Eusko Jaurlaritzako Kultura Sailaren laguntza izan du liburu honek.

Lehen argitaraldia: 1999ko iraila
Bigarren argitaraldia: 2000ko azaroa


Gudari Etorbidea Z/g. Parke Kulturala - 20040 - Andoain
Tf: 943 300 621
ISBN: 84-930227-7-2
Legezko gordailua: NA. 3.294-2000
Inprimatzailea: Gráficas Lizarra, S.L., Estella

# Aurkibidea

# 1. Tentaldiak

## BILBOKO ZEZENPLAZAN

Nik entzuniko lehenengo bertso saioa 1960an izan zen, Bizkaiko txapelketako finala, Juan Mugartegik irabazia. Ez nintzen lar ohartu irabazleaz, bigarrenaz, ez ganerako partaideez. Beharbada bertan saio haren radiografia argi jaso izango eban nire buruak, baina ez eban luzaro gorde. Nire gomutan geratu direnak zezenplaza bete jente eta bertsogintzaren egintza orokorra dira. Xehetasunak hor egongo dira nonon, nire barruko zokondoren batean, psikoanalisiari interesa balekioz, baina nik tiratuta ez dabe etorri gura.

Bilboren bihotzean eta zenplazaren erdian neure burua irreal sentitzen neban. Zezenak eta toreroak, orain daukadazen balorapen guztiz kritikoak alde batera itxita, mito bat ziren niretzat orduan. Plazako hondarrean, inoz hurretik ikusi barik nituen (orduan telebistarik ez zegoen, nire begientzat behintzat) eta ondino be ikusteko nagoen animalia harrigarri hareik (animalia baten hurtasuna bere begien espresinoa atzeman ahal izatetik neurtzen dot) neuri begira imajinatuz, nire gorputz uxterra dardaratu egiten zen. Zezenari begiratuko neutson, hak liluratzen baininduen, eta toreroak traba egiten eustan. Honek be txunditzen ninduen, bai, baina gero ohartu naz ez zela beragaitik, zezenagatik baino.

Zezenak, toreroak, zezenplaza, ordurako nahikoa kontzientzia, baita etsaigo be, hartua neban erdal munduaren adierazle tipikotzat ikusten nebazen, hiria bera be erdalerri arrotza zela. Nire Bilboren ezagutza ezer gitxi zen Atxuriko geltokitik Begoñako eskilaretako geltokira ibibideaz harago, ibilbide gazigozoa, seminariotik etxerantz, urtean hiru bider, pozari jarraitu

ezinik, eta bueltan tristura ekarri ezinik, maleta handi baten azpian. Alboetara luzatzen, okertzen eta ezkutatzen nekutsen kaleak mundu arrotz eta badaezpadako baterantz norabide galazoak ziren. Bat batean, Bilboren bihotzeko zezenplazaren erdian, neure munduaren agerraldi miragarrietako baten entzule nintzen. Jentetza izugarriaren presinoa eta emozinoa sentitzen nebazela, («Euskel Herri guztijje etorri'ok hona ala?», ninotson alkarregaz joan ginen abadeki lagunari), oholtza ganean, oso urrun, figura batzuk hautematen nebazen, zutuntzen eta jesarten ondo ikasi barik zirudienak, baina kantatu egiten eben, agintzen jaken txandan eta gaian, Alfonso Irigoien izeneko gazte pipor baten esanera. Bertsolari batzuk helduak ziren, niretzat orduan zaharrak, gaur ni nazen baino askoz gazteagoak baziren be, aurreko urte bietako txapeldun Enbeita, «Taket» zinotsoen bat, Pujana, Alberdi, baita gazteak be, Mugartegi, Azpillaga... Honeina gogoanago daukat, Mugartegi txapeldun eta Azpillaga bigarren geratu baitziren.

Entzule paralizatua nintzen. Saiorik gehiena ukondoak belaunetan eta burua atzamar guztiakaz arakatzen igaro neban. Bueltan etxean bekoki inguruak ederto markaturik aurkituko neukezen, espiluari begitzeko ohiturarik izan bagendu. Eskaratzean, armario ganeko horman, espilu txiki bakarra zegoen, egonak eta lantzean zaplada batek pitzatua, baina etxetik urteteko bakarrik begitzen geuntson, inoz be ez bueltan, arpegia mankatuta edo ez bagenkarren. Buruari helduta, erpuruakaz belarri osteari sakatuko neutson, sarritan ezer ez entzuteraino, txaloen eta eupaden burrundada besterik. Ezin neban entzun, ezin neban begitu, hain bainengoen estu eta bildurrez, hasten ebena amaituko ete eben, eta inkognita hori bertso bakotxean errepikatzen zenez, burua jasoten nebanerako, («amaittu jjok, ondo amaittu jjok!»), barriro ezkutatu beharra zetordan. Nire kezka nagusia zen bidean toton egingo ete eben, baina, danen bertsoak eta bertso danak amaitzen zirela, nire aldez aurreko espektazino mireskorra benetako mirari bihurtuz zihoan, azkenean emozinoaren intentsitatea lasaitasun definiti-



boaren altzoan iragazi zen arte, betiko.

—Zelan? —itaundu baleuste —, Itzel! Siñesteko be holakorik! —erantzungo neukeen.

—Zelan kanteu deurien esan gure jjoat, ondo, txarto, erdizke...

Orduan ez neukeen baloratzen jakingo, ez neuskion itaunari zuztarrik hartuko, zeozer dudan ipintea bailitzan. Berbak eta hotsak entzuten nebazen, egintza osorik burutu zen, zer ardura eben berben loturek eta esangura partikularrek? Jentetza geroz beroagoaren txaloak entzuten nebazen, neuk be gogoz txalo jo neban, eta niretzat miraria gertatua zen: egia zen Euskal Herrian bazirela gizonak (orduan ez zegoen andrazkorik), bertsoak batbatean hasi eta amaitzeko dohaidunak, zenbat eta ezikasiago, hainbat miragarriago. Etxerakoan ez neukan, ez, espiluaren akordurik.

Egun haretan ez nintzen umea. Hemèretzi urte baneukazen eta abade karreran aurrera ninoan. Sei urteko batxilergoaren edo «humanitateen» ondoren, hiru urteko filosofi ikasketen bigarrena amaitu barri nintzen. Horrez ganera, filosofiako urteetan, Euskal Herriagazko kontzientzitze leherkorra bizi neban, sasoi haretantxe lokatzen hasi zen seminarioko egitura diziplinatsu eta hertsiki menkoiaren barruan. Menkoi, bai eleiz hierarkia eta ordenamentuagazko, bai hierarkia eta ordenamentu politikoagazko. Frankismoa sasoirik onenean zegoela, separatistak, masoiak eta demoninoak alde berekoak ziren. Abadeentzat «politikan sartzea» gatxesgarriago zen «gonetan jaustea» baino eta politika hori errejimen inperantea dudan ipinten eban edozein aukera zen, batez be abertzaletasuna. Nik neure kautan, eta geure nukleo isileko baina hazkorretan, hori guztia nahikoa argi eta indartsu iraulia neukan dagoeneko.

Esan barik doa ofizialismo kupidabage haretan erdera zela (latina eta gaztelania) komunikabide bakarra eta euskera eta euskal usain oro guztiz susmagarri zirela, baita jazarriak be. Halan be,

hizkuntzagazko behintzat, ezin eben diskurtso kondenatzaile ganorazkorik garatu euskera lantzen hasita gengozenon aurka. Ahal eben guztian izorratzen ginduezen, baina aurrez aurre ez zeuken argumentu konbintzenterik, geu be ez baikinen kamutsak argumentuak josten, batez be kontra zirenean. Gelak miatzera noznahi sartzen zen irakasle batek ezin eban jasan nire mahai ganean beti euskerazko libururen bat zabalik aurkitzea eta bere klaseetan, hainbeste ikasleren artean, behin eta barriro zutunduazoko ninduen, lezinoa emon nengian, ea hutsean harrapaturik, euskerari gitxiago ekiteko arrazoia aurkitzen eban. Zorionez, ikasketetan ondo nenbilen eta, haren intentzinoaren barri jakinik, nire urgulua sobran arduratzen zen, jokoz kanpo harrapa ez nindeian, eta halan, berbabidea sortzen zenean, defendatzen nintzen: «Zergaitik ez dodaz, asignaturak behar den moduan eroanik, ordu libre batzuk euskera lantzen egingo?».

Zati bat halantxe zen, izan be, jolasaldi eta gaueko ordu ugari emoten baineutson euskerari, baina koartada horregaz baita ahalik ikastordu gehien be, asignatura sorta ha itxuran eroateko, denpora izentatuaren erdia nahikoa izaten baineban. Hemeretzi urterako, euskera asko irakurria neukan, bertsoak be (Arrese-Beitia, Kepa Enbeita, Txirrita, Etxahun, Elizanburu, Xenpelar, Otaño...) ehundaka nekizen buruz. Bilboko zezen plazan, beraz, entzule aditua edo gitxienez ohartua izateko gaitasun guztia suposatu behar jatan, baina, talentuaren hutsune aurrikusgatxen bateri esker, ez nintzen bertsoen eduki teknikoaz eta tematikoaz jabetu. Bat bateko bertsogintzaz neukan idealizazinoa praktikan posible zela, hots, hasi eta geratu barik amaitzeko gauza zirela konprobatzea, nahikoa eta lar izan zen, nire liluramena ganezkatzeko.

Lutxanako osaba-izekoek udaro ikustera eroaten ninduen zirkuko trapezisten ikuskizun niretzat miragarrian be, harein zilipurdi artistikoek baino gehiago txunditzen ninduen ikusteak zelan, halako altuera bildurgarrian, alanbrearen punta batetik bestera garaile iristen ziren, bidean jausteko planta larriak eta dana egi-



nez. Zirkuan sarri heltzen neutson burua Bilboko zezenplazan ia eten barik gordeko neban. Trapezistak ez lez, bertsolariak neure barne mundua ziren, antza, eta horrek arriskuan, liluran, mirarian, neu be arteko egiten ninduen. Bertsolaritza euskaldunen mirari esklusibotzat neukan orduan. Euskera munduko hizkuntzarik zaharrena eta ederrena zen eta bertsolaritza hizkuntza horretantxe bakarrik garatutako jarduna, munduan bardin bakoa. Horixe ikasi neban, horretaz harrotzen baitziren euskaltzale jakintsuak. Ondino ez nenkien Oteizaren bertsolariari buruzko sublimazinoen barri, baina Bilboko zezenplazan hak formulaturiko hustasun gainezkorra sentitu egin nebala uste dot. Hutsik nengoen, egon be, bat bateko bertsogintzaren ulermenaz. Zer ardura dautso ignorantzia zirrara handiosen iturri izateak, benetako zirrarak badira?

## GERNIKAKO EMOZINOAK

Hurrengo bertso saioa handik pare bat urtera entzungo neban, hogeta bat urtegaz. Hara-hona ibilteko sasoi eta gogo faltarik euki ez arren, abadekiok udako oporrak bakarrik genduzen etxean eta eurak be eleiza inguruan eta bokazino dibinoaren txondorra zaintzen. Nahizta barrutik askatu samarrak izan, eta ni ordurako hasia nintzen izaten, ez zen erreza hesi diziplinario haretatik urtetea. Jazkeratik hasita, gure ibilerak oso mugatuak eta gure dibertsinoak guztiz bereiztuak ziren beste gazteakandik, batez be neskakandik, eta ez zeukan erremediorik, gu hurreratzen ausartzen baginen, eurek iges egiten eben-da. Bertso saioak, sasoi haretan eta nire inguruan banakak izanaz ganera, gure eguneroko meza obligatuagaz zeharo alkargatx zen erromeri giroan gertatzen ziren beti. Halan, Bizkaiko beste txapelketa bat iritsi zen, zeinaren finalerdia Gernikan zen eta ni oporretan etxean harrapatu ninduen. Txapelketa bat ez zen erromeria mundutar bat, adierazpen kultural bat baino, nik orduan segurrenik adierazpen literariotzat sail-

katuko neukeena. Beraz, hara joatea ez zeitekeen gatxetsia izan. Artean eskrupulu moralak gaindituak neukazen, baina jenteak ez txartzat hartzea be neurtu behar zen, azken batez herri baten zerbitzurako uste zintzoan bainenbilen abadegintzan, eta zorionez, euskaldunen aldetik, gatxespena barik alderantzizkoa hautematen neban bertso inguruan, nahizta, seminarioan jakitera, (eta jakingo eben), banenkien barriro be nire susmagarritasuna areagotu egingo zela. Beharbada jente batek be horrexegatik apur bat muzin egingo eustan, urtenegi agertzen nintzelako. Txapelketara joatea, ostera, neure norabidearen baiezpentzat neukan eta ohiko abadegai baten irudi desherritua lokatzen nebala susmatzeak arrazoi bat gehiago emoten eustan. «Hi be hemen?» itaunaren harridurari beste galdera baten harrotasunez erantzungo neutson: «Nungoa nok, ba?».

Menditik oinez errepidera jatsi, Autzaganen autobusa hartu eta, neure kautan ilusinoa kabitzen ez jatala, Gernikara heldu nintzenean, hain herri handian eta halako jentetzan murgiltzea nire mundutiko isolamentu ez hain gogozko harentzat hordimena izan zen. Gorozikako ezagun batzuren artean sartu nintzen eta gogoan daukat zelan, arkupe batzutan, entzun neban: «Horix'ok Azpillaga». Hau orduko Bizkaiko txapelduna zen eta ikaragarri txokatu jatan halako mutil zatia —Azpillaga planta itzeleko gizasemea izan da sasoian— zapatak ortozik zituela ikustea, arkondara zuriagaz. Zapatak nasai samarrak izan arren, haren oinek bildur barik zapaltzen eben espaloia eta atzerik hara, oso hurretik, begien ahalmen guztiakaz obserbatu nebazen haren pausakera eta gorpuzkera, ezker-eskuma lagunez aldamendua bera. Praka barrenen eta zapata baltzen bitartean, oinen zuritasun txatalak eta tarteka orkatila txonpoak agiri jakozen eta pentsetan neban: «Nungoa et'ok hau?». Banenkien, Markinatik harago, Berriatua zeritxon herri batekoa zela, baina ni Trabatutik harantz, Iruzubietaraino bakarrik, pare bat urte geroago pasatuko nintzen, seminariotik motordun lagun bategaz (familia guztia Ameriketara joan jakolako, motorra seminarioan eukitzen iztea lortu eban) egindako eskapaldi batean.



Ez daukat gogoan finalerdi haretan Azpillaga kantari ala entzule egon zen. Beharbada, txapeldun lez, finalera zuzen zihoan. Ez dakit eta jakiten errez neuke, bai xehetasun hau, bai kondaira honetan agertuko diren beste hamaika, baina nire helburua ez da egia gertatua, egia gogoratua baino, oroimenean gelditu jatana eta jatan moduan, aldrebestua bada be. Azpillagak Gernikan kantatu baeban, haren zapata oinutsek (hau ez daiteke oroimenak sortutako egia izan!) denporagaz beste guztia alboratu eben.

Badakit Lopategik kantatu ebala, gero Bilbon txapeldun izango baitzen. Aurreko urte bitan edo, eskualdeko lehen saioan kanporatua izaten zen eta inork ez eutson haren izenari federik emoten, baina urte haretan eskualde, finalerdi eta final, dana aurrean eroan eban. Lopategigaz batera Arregi «Altzu», Ibarzabal «Buzterri», Deunoro Sardui eta beste batzuk izango ziren. Mugartegik be ez daukat gogoan kantatu eban ala ha be finalerako zen, aurreko urteko bigarren lez. Dakidana da urte bi lehenagoko zezenplazako finalean baino apur bat gaiago nintzela, bat bateko bertsoa ulertzeko. Beharbada Gernikako gomuta haretan saio bat baino gehiago kurutzatzen jataz oroimenean, nire irudimenak behin goitik behera ikusten baitau, Juntetxe aldetik beheko anfiteatrora begira banengo lez, behin udaletxeko plazatik balkoira. Saio berean behetik gora edo alderantziz mogitu ez banintzen, (zeitekeena hori be, orduan geldi egoteko baino ikusmin handiagoa baineukan), saio bat baino gehiago nahastu dira nire Gernikako erretratuan.

Bertsolari guztiakazko miresmen orokorraren barruan, (orduan ez neukan buruari helduta egon beharrik, hasi eta amaitzeaz beste balio batzuri begitzen hasita bainengoen), Lopategiren bertsokera deigarri egin jatan. Gauzak ezbardin eta apur bat txoketako moduan esaten ebazen. Ondo ulertzen jakon, ideiak argi adierazoten ebazen, bertsolaritzaren «misterioa» haren ahoan ia ulergarri (desmitifikatua, beraz) ikusten neban eta, erara zeto-

rrenean, oso neure egiten neban berotasun bat somatzen jakon, batez be abertzaletasunezko puntadetan. Orduko entzulea be, azpi-azpian, sentipen erreprimitu harexen indarrak zerabilen bertsolarien atzetik. Artean karreran aurrera ninoan eta pentsa neikeen: «Neuk ezingo ete neukek holan kanteu?». Abade-bertsolari izateari, pentsatu izan baneu, kontradikzinoa barik bultzagarri doblea eritxiko neutson, baina orduan Lopategiren antzera kantatzeko ahalbiderik ez neban irudikatzen, ez ausartzen ez nintzelako, otu be egin ez jatalako baino.

## TRABAKUKO SAN JOANETAN

Hirugarren saioa abadetzan entzungo neban. Hogeta lau urtegaz abadeturik, irail batez aurkeztu nintzen neure lehenengo destinora, Gizaburuaga izeneko herri txikira, Lea Ibarrean gora Lekeitiotik sei bat kilometrora dagoena bera. Hurrengo urteko San Joanetan, hogeta bost urte nituela, Lasarte eta Agirre zegozen iragarriak Mallabiako San Joan auzoan, Trabaku azpian. Gizaburuagako mutil bati esan neutson: «Hi! Hamarretako mezostien jung'aitxuk Trabakure, Lasarte eta Agirre entzutera?». Baietz. Motor bitan abadea eta hiru mutil, bat nire atzean eta beste biak eurenean, han goaz eguerdi ingururako San Joango ermita ondora. Orduan Mikel Zarate idazle eta euskaltzale handia zegoen han abade eta laster hartu genduen lasai egoteko konfiantza. Ez daukat gogoan plazan saiorik egin eben, edo, egin baeben, ez genduen entzun edo, entzun bagenduen, ez jat gogoan geratu. Bai, ostera, oso gogoan daukat mahaian jesarrita egin ebena, ni euren aurrez aurre. Gizaburuagatik Trabakura bidean nire motorrak zelako poza zeroan eta San Joango ermita ondoko lokal haretako mahaian Lasarte eta Agirreren saioa zein adi eta zirraraz entzun neban esaterik ez dago. Artean bertsolaritzaz informazino handia neukan, asko irakurria nintzen, burua bertsoz beterik neukan.



Behin seminarioan buruz nekizen bertsoak kantetan hamar ordutik gora beharko nebala kalkulatu neban. Baina bat-bateko bertsogintzan, abade egin aurretik, Bizkaiko txapelketako hirulau saio bakarrik entzuna nintzen eta halan, hain aurrez eta hurretik entzuten nebazen lehenengo bertsolariak Lasarte eta Agirre ziren. Gero han-hemen hasiko nintzen saioak entzuten, batez be orduan ugari ziren txapelketakoak, epaimahaiko egiteko gonbita be onartu neban, bai Bizkaiko, bai Euskal Herri mailako txapelketetan, baina oso ezbardina da entzule ala epaile izatea. Guzurra badirudi be, epailearentzat gatxa da bertsoa ondo entzutea.

Urte batzuren distantziatik begiturik, nire orduko burua nahikoa bitxi atzematen dot, entzule izan aurretik, bertsolari «famatua» bainintzen. Famatua ez hainbeste bertsolariagaitik, abadeagaitik baino. Sotanadun bat plaza agirian eta erromeri giroan kantuz ikustea, lan badaezpadako eta lotsabako samarrean, euskaldunen begi bildurtuentzat ezuste nabarmenegia zen. Gerroste luzearen ondoren, andrazkoak edo neskak barriro plazaratzen hastea gertaera sonatua eta eurentzat gatxa izan bazen, ez zen gitxiagorako izango meza santuan sermoilari ikusi barri eben abade bera orain plazan bertsolari entzutea, auskalo zelako gauzak esaten, ze nik orduan, zuzen ustekoak aldrebes kantatzen trebeagoa banintzen, pentsa hasieratik oker hartuak zelan burutuko nituen.

## KANALAKO MEZA BARRIA

Urtebete abade neroala, Kanalan Josu Naberan nire lagunaren meza barria zen. Orduan asma zeitekeen abaderik frankistarena zegoen Arteagan parroko. Kasu nabarmena eta inguru guztian bildurgarria zen harena. Gerratean eta ostean gorri famako familiei kalte handiak egina zen. Gerroste guztia (hirurogeita seian gagoz) Arteagan egin eban eta bertan hil zen azkenean, «ohean zoritxarrez», bateri baino gehiagori entzun neutson moduan. Artea-

garrek, euren eleizako pulpituan jasorik, bandera espainolaren ikuspen apalgarria pairatu behar izan eben haren denpora luze guztian. Behin nonor, isilean, ha kentzen ausartu zen eta hurrengo domekako sermoian, beste bandera barri handiago bat erakutsiz, esan ei eban: «Hurrengo kentzen dauenari hauxe!», sama moztekoa eginez. Txarto esan dot. Erderaz egin eban mehatxu, harek ez eban euskerarik sekula erabilten-da. Artean mezak latinetik ama-hizkuntzetara pasetan hasiak ziren eta Naberanek euskeraz egingo ebala jakinazo eutson Don Luzio parrokoari. Hau suak hartu eban. Bera Arteagako parroko zeno, han ez ei eban inork euskerazko mezarik emongo. Orduan Josu Naberanek bere meza barria Kanalara eroatea erabagi eban, hango abadeagaz berba eginda.

Don Luziori halako plantorik inork ez eutson sekula egin. Espektazino itzela sortu zen, batez be ea Arteagako herritarrak euren parrokoari hain marro agiria egiten ausartuko ete ziren, domeka haretan Kanalara joanez. Meza ostean, Muniategi eta biok izango ginen bertsolari, aurreskulari eta abarrekin batera. Gizaburuagan bigarren meza emon eta, Ereñon Muniategi harturik, baginoazen geure motorrean eta, Muruetaganen behera hartzean, Arteagan txapliguak ziren. Barruak zausk egin eustan. Arteagarrak ez zegozen, antza, euren Kanalara joatea disimuluan pasetan izteko. Hemen jentetza handia batu zen, goardia zibilak be ugari baztarretan. Emozinozko tentsinoa nabari zen, pozezko irribarreak, ahopeko berba gozatsuak. Herri guztia Kanalan zen, Don Luzioren sare inkondizionaleko dozenaren bat falangista izan ezik. Beste herri batzutatik be jente asko batu zen eta meza barri ha (sermoia be halakoxea izan zen), liturgiaren babes konfesionalean, Euskal Herri zapalduaren baiezpen bat izan zen eta, zelan ez, Arteagako parroko ezin frankistagoari egiten jakon lehenengo mendeku publikoa eta biribila. Egun hatakoxe amorrutik harako gaisoak eroan ei eban Don Luzio beste mundura, azken nahikoa tristea eta luzea igaro ondoren.

Kanalako pilotalekuan, meza osteko ospakizunean, aurresku, dantza eta gisako ekitaldien ondoren, bertsolarion txanda iritsi zen. Oholtzako eskilaran gora ginoazela, albo batean zegoen andra moltzo batetik entzun neban: «Ene! Barriz be mezie dekau ala?». Sotanadun bat igoten ikusten baiteban. «Entzu'ok hor atzien zer diñuen? —itaundu neutson Muniategiri, igonaz batera—. Meza edarra entzun bi'jjuek ointxe, horren esperantzan bajjaozek». Geure saioa eginda jatsi ginenean, ez zegoen dudarik askorentzat egun trinko haren barruko ezuste bat gehiago izan zela abade bat bertsotan ikustea. Zirkunstantzia hareitan ez dot uste pasadako arinkerietan jardungo genduenik. Handik urteetara, baten batek egun haretako argazkiak eskuratu eustazenetik, (sotana galantez agiri naz, arkondararen lepo zuria ganerantz etarata), nire bizitzako dokumentu maiteenetako bateri begitu ahal dautsot.



## GIZABURUAGAKO DEBUTA

Kanalako meza barria uztailaren hasiera inguruan izango zen. Pare bat hilabete lehenago, Gizaburuagako neure parroki herrian egina neban debuta bertsolari lez. San Isidro egun handia zen orduan eta nik, ilusinoa eta adorea zerion abade gazte harek, eginahalak egin nituen, neure lehenengo San Isidroetan herrian jairik ederrenak izan zeitezen. Programan ezuste bitxi bat agertu zen: «Bertsolariak Abel Muniategi eta Xabier Amuriza». Batek esango eustan: «Egijje da berorrek bertsuetan ein bi'skune?». Konfiantza gehitxoago zeukanak esango eban: «Zeuk kanteu bi'zule? Ikustekue ixengo da geure abadie bertsuetan!». Eguna hurreratu ahala, banerabilen larritasun puntu bat, baina askoz handiagoa zen nire irrika eta unea heltzeko gogoa. Banitatea esango neuke, edo herriaren ederra irabazi nahia, sasoi haretan nire abade jarduna zintzoegia eta gardenegia izan ez balitz, hain apasionanteak ziren beste hainbat arlotan.

San Isidro egunak jente handia ekarri eban Gizaburua-

gara, herrikoez ganera. Mezako sermoian, eleiza betea ustez arreta osoan neukala, nire pentsamentuak plazara ihes egiten eban: «Zer pentseuko ete jjuek honeik, gero bertsotan ikusi naijjenien?». Iritsi zen unea eta, jatorduak egiten nebazen ostatuko balkoitik plazara kantetan hasi ginenean, isiltasun totala egin zen. Entzuleak eleizan baino adiago nabari nebazen. Zeozer bazekienek euren espektazinoa baitetsi gura eben eta ezer ez zekienak, edo herriko abadeak bertsotan egingo ebalakoa erdi broman hartua ebenak, ikusten ziharduena sinestu ezinik zegozen. Buruak alborantz okertzen ziren, belarrira esaten lez: «Honek nundi jjakik bertsuetan?», edo: «Abadiek honetantxe hastie besterik ez genduan biher», edo: «Neskatan be laster eingo jjok horrek». Bertsotan kunplitzeko moduan egingo genduen, baina auzia ez zen hainbeste zelan, egintza bera baino. Esan barik doa arrakasta eta txalo ugariko saioa izan zela. Amaitu zenean, erdi olgetan, erdi benetan, danek esan nahi euskuen zeozer. Gehienentzat ezuste handia eta zenbaitentzat eskandalu txiki bat izan bazeitekeen be, ez daukat ahaztuta zer jarrera karinosoa erakutsi euskuen. Nire eleiztarrek ezin eben euren harrotasuna ezkutatu alberrikoen aurrean, zeinetako batek, taberna bete-betean, gizaburuagarren kontrako puntadatzat bota eban: «Honek eztotsue hemen denpora luzerik eingo». Gizaburuagar batek erantzun eutson: «Ixen lei horrenbeste, baiñe, iñora mogitzekotan, eztot uste zuen herrire jungo danik». Iluntzean, jaia amaiturik, abadetxeko eskaratz zaharrean bakarrik aurkitu nintzenean, ezin izan neban ekidin egunaren pozari gauaren tristura ganeratu zekion.

Abadetzako lehen pare bat urteak sotanaz egin nituen. Artean baziren hain barik jazten zirenak, orduantxe baitzen gure mendeetako bele-uniformea kristinau jantzira aldatzen hasteko garaia. Esan beharrik ez dago begirako hain aldakuntza nabarmen ha eleiz sektore gehienek eta eleiztar askok nasaikeriatzat, mundukeriatzat hartzen ebela. Lehenengo abade «laikoak» oso markatuak ziren, baina urte gitxitan goitik behera aldatu zen panorama, itxarotekoa zenez, gitxi-asko danak baitzegozen trapu baltz harein azpitik euren gorputz freskoa bistaratu guran. Aldakuntza haregaitik maiseatu ginduezen eleizgizonak handik denpora laburrera hain txairo eta artaz eraldaturik ikustean, aurpegiratuko geuntsen: «Guk bidie edei eta zuek aprobetxeu, ezta?». Halan be, oso gogoan daukat, orduko beste abade aurrelari batzuek lez, ez nebala prisarik hartu, sotana izteko. Jakinki eta berariaz egin genduen hori, jenteak ez zegian gure errebeldia sotana jaurtitzeko gogoagaz bat egin. Gure burruka indar interesatuek egotzi gura euskuen «gona kontua» baino askoz zabalago eta sakonagoa zen eta ez genduen geure jokabidea, «salapen profetikoa» esan zeitekeena, zirkunstantzia friboloakaz nahastu gura. Bizpairu urteren kontua izango zen dana be, baina garai hareitan, Bizkai aldean behintzat, abadeen mogimentuak denpora laburrean bide luzea egin eban.



## SOTANARI AGUR

Hainbat herrik ikusia ninduen sotana eta guzti kantetan, baina niretzat be heldu zen erabagi eguna, alzheimerrak be ahaztuazoko ez daustana. 1967ko bagil ingurua izango zen. Gizaburuagan ohitura zen gazteriak urtean gatzatu jan bat egitea. Herriko baserririk urrunenean, Urrexolan, bazkaria izaten zen eta ganean gatzatu asea. Gero handik Nabarnizera joko genduen, hemendik iluntzean Aulestira jatsi eta batzuk oinez, beste batzuk autobusez, gau nahikoa aurreratuan amaituko zen itzulia. Mendirik mendi eta erromeri giroan ibili behar zenez gero, pentsatu neban: «Haux'ok egun aproposa herrijjen da inguruen sotana barik agertzeko». Terrenoa apur bat prestetako, batzuri zeozer esana izango neutsen, baina domekako bigarren meza emon ondoren, abiatzeko zain zegozen neska-mutilen aurrera, abadetxetik «prakadun» urten nebanean, begi guztiak noraezean hauteman nituen,

neskenak batez be, irribarretik barrera bitarteko atekan norantz hartu ez zekiela. Goitik behera eta behetik gora errepasatzen ninduen, matrailak gori neukazan, lotsaz inguraturik, baina freskura batzuri jareinez libratuko nintzen lehen kolpetik. Gazteak errezago jarten dira inpresino barrietara, baina adineko jentearen aurrean txokea nabariagoa zen. Ordurako, herrian ondo ezaguna nintzen, maite be baninduela uste dot, eta nire itxura aldakuntza ontzat eta karinoz hartu eben. «Gixon politxe zaoz ontxe» esango eban batek. «Abadiek be zer die, ba, prakadunek baiño?», beste batek eta nik erantsiko neutsen: «Zu! Ez pentseu ni oin arte praka barik ibilli nazenik gero!».

Urrexola oso aparte zegoenez, Gizaburuagara bakan jasten ziren, Nabarnizerantz joera gehiago baitzeuken, eta etxeko gizonak bakarrik ezagutzen ninduen. Andreak eta seme-alabek entzunak izango ebezan herriko abadearen kontuak, beharbada inoz eleizkizunen bateko distantzian ikusia ninduen, baina ez ninduen ezagutzen. Urrexolako atartera heldu ginenean, etxekoandreak harrera eskuzabala egin euskun, pare bat alabak mahai atontzen ziharduela.

—Ondo etorri zarie? —Urrexolako andreak eta mutil batek erantzun:

—Etorriko ez giñien, ba, abadie be geugaz genkarrela?

Abadie? Abadie? Urrexolako andreak eta seme-alabek muzin egin eben. Mutilak barriro:

—Hemen daozen danak ezautz'ozuz? —Andrea danei begitzen hasi zan, esanez:

—Ezautuko eztitxut, ba? Zuek Goiketxekuek, zu Iruarritzakue, zuek Laxiarkuek... —Apur bat ostean apropos nengoena seinalatuz, neska batek itaundu eutson:

—Hau be ezautz'ozu? —Urrexolako andreak buruari atzerakada txiki bat egin eutson, enfokea zehaztu guran.

—Horrexeri eztotset iñungo antzik hartzen.



—Nor ixen leijjen bez?

—Hau ezta ixengo Gizaburuko abadie baiñe! —Atartea burrunbatzeko moduko barre algaran baietz ulertu behar izan eban emakumeak—. Jesus Marijje! Hau da orduen gure abade famauori?

Arratsaldean, gatzatua belarrietatik zerigula, talde batek Aulesti aldera hartu eban eta beste batzuk Nabarniztik bueltan, neu tartean nintzela. Etxerako gogorik edo motiborik gitxien neuk neukan han. Gizaburuaga eta Nabarniz «Nabarnizmendi» izenekoak bananduta dagoz. Urrexolara ordubete ona behar da, dana aldasgoran, eta hemendik Nabarnizera beste horrenbat, ganez gan eta behera eginean, orain inor bizi ez den Goiherrin zehar. Nabarniztik oraindio urrun samar, bazen bidean «kanteretakoa» esaten eutsoen etxe bat eta han andra bat agertu zen etxe aurrera, txakurrak isilduazoteko atxakian, zer prozesino zetorren ikustera. Berbetan minpekorik ez zeukan eta gure koadrilan be ez zen, arrastiaren kinka animatu haretan, tentatzailerik falta. Hak ez eban Gizaburuagako gazterik ezagutzen, bat edo beste izan ezik, baina honeik bazekien haren barri eta autu labana sortzen zaleak ziren.

—Arratsalde on, etxekoandra!

—Halan emon Jainkuek! Zuek gizaburuarrak zarie, ezta?

—Batzuk hanguek gara, bai. Gizaburun ezin giñen sosegeu ta Nabarniz astintzera gatoz.

—Alperrik zatoze orduen, hemen lehen be nahikue jente astiñe dao-ta.

—Haixiena ixengo da.

—Haixiena? Gizaburuko errotara artue ta garijje nundik jut'ok, ba?

—Domeka arratsaldie ta elixaldera osteratxu bat eztozu ein biher?

—Osterie etxe bueltan jjekuat nik. Hemen, antijuek jantzi arren, biherrak etxuek berez korriduten.

—Ba, ontxe dekozu aukerie, laguntasunik biher bazendu.

—Merijjenda edarra bai jango zeunkie zuek, etara ezkero.

Emakumeak beste edozein mutili lez berba egiten eustan eta horrek nire lagunak areago leherrazoten ebazan. Batek esan eutson:

—Gizaburun holakoxe baserritxar kurijjosuek daukeuz.

—Hori baserritxarra? —hots egin eban nigaitik —. Baserritxarra ixeteko, nabarmentxue jjirudik horrek.

—Jesus, andrie! —kexatu nintzen —. Horixe da gixonari aldekuek kanbijjetie!

—Gixona ixengo zara, baiña baserritxarra ez kontixu.

—Eta abadie dala esango baleutsue? —jaurti eban beste batek.

—Hori abadie? Leku onien jjauk gure fedie!

—Hauxe da, ba, Gizaburuko abadie!

—Horreri pekatuek konpeseute, parkatzekuek badie, Jainkue eztot gitxi zuritxu.

Kostatu jakon andreari abadea nintzela sinestea, baina azkenean autortu eban: «Banenguen, ba, ni esku fiñeijjek eukozala!». Gizaburuagako neska-mutilek txizak ez besteak egin ebezen harrobietako etxe haren aurrean. Gero Nabarnizko eleizaldean be, plazan zein tabernan, aire bardintsuak jarraituko eban, kontraste nabarmenagoz ganera, orduan Nabarnizen, beste herri askotan lez, oso abade atzerakoia eta dominantea baitzegoen, astelehenero Gernikan angulak bazkaltzeko penitentziari hutsik egingo ez eutsoenetakoa. Herri Gaztedik edo antolaturik, ez naz garbi gogoratzen, behin berbaldi bat eskatu eusten, Nabarnizen egingo zena, eleizaren lokal batean. Abadeak baimena emona eban, zenbaiten harriduraz, baina, hizlaria nor izango zen jakitean, atzera egin eban. «Ni nazen artien, Gizaburuko abaderik ez da hona ezetan sartuko». Nabarniztik Aulestira jatsi ginen, bidean hainbat auzo pasaturik, eta, gaua aurrera zihoala, batzuk autobusean, beste batzuk oinez, oinpeak ederto zigortuta heldu ginen herrira. Gizaburuagako gazteak egun haretako nobedadeagaz zenbat gozatu ziren kalkulatzerik ez dago. Oraintxe be, hainbeste urteren ondoren, ibilera ha autugai izaten da eta batzuk neuk baino hobeto gogoratzen dabez xehetasunak.



## SANTA EUFEMIAN ABADE PRAKADUN

Ez zen, halan be, ha izan, sotana barik estrainatzen nintzen lehenengoa, aurreko urteko irailaren hamaseia baino. Gizaburuagako gazte talde batek Santa Eufemiara oinez joateko plana egin eban eta neu be tartean sartu nintzen. Herritik sotanaz urten neban, baina, alde haretako azken baserriak mendirantz pasatutakoan, sotana motxilan sartu neban. Gona hareikaz ez zegoen mendian sano korritzerik. Ibilera animosoa izan zen, bidean hamarretakoa eginez eta zahatoari lantzean-lantzean zirristada luzeak kenduz. Eguerdian Santa Eufemiako zelaira heldu ginenean, laster zabaldu zen barria. «Gizaburuko abadie sotana barik jabik hor!». Banenkien zer aurkituko neban eta ahalegintzen nintzen neure lotsa gainditzen, behin zeharkako freskurekin, behin azalpen karinosoekin, behin berba neurtuekin, segun nogaz topo egiten neban, baina ez zegoen nobedadearen morboa saihesterik, ezta zenbait begirada gogor biguntzerik be. Zelaitik tontorreko ermitara harmailadi luzea eta estua dago, oso erripea, eta halako egun jentetsuan goranzkoek eta beheranzkoek nahikoa lan izaten dabe alkar apartetan. Goranzkoak nekatuta etorri ohi dira, batez be adin samarrekoak, eta honei baztartzeko eskatzea bihozbagekeria litzateke, baina, harmailetatik urteteak be, bedar xehean laban eginda, hankaz gora joateko arriskua daukanez gero, gehienek galtzada barruan kurutzatu gura izaten dabe. Ermitako jira eginik, beherantz gentozen. Erdi inguruan, beste askoren artean, hirulau emakume zetozen, arnasa kostata zekardela, eta, hurreratu

ginenean, batek, arpegia beteko ezustean, hots egin eban:

—Ene! Gizaburuko abadie prakakin!

—Ze nahi zendun, ba? Kantzontzilluekin etortie?

—Jesus! Horixe be ikustekue litzateke!

Emakume hareik bazeroen Santa Eufemiari zer kontatua. Gitxi gora behera, tonu horretantxe pasatu neban eguna. Eguerdian ohitura zen Aulestiko udaletxeak herriko abadeei eta alberrietatik batzen zirenei bazkaria emotea, harrizko mahai baten inguruan. Niri be aulki bat zegodan, prakadun bakarra sotana baltzen artean. Aulestiko orduko parrokoa Don Emilio Kortabitarte zen, nik abadetzan eta bizitza guztian be tratatu dodan gizonik maiteenetakoa. Abade gazteen jokabide kontestatarioa, ordurako nahikoa mogimentu eratua osatzen ebana, begi onez eta pozik ikusten eban, baina urratsak herritarrek ulertzeko modukoak izateari ardura handia zemotson eta esan eustan:

—Hi! Herrira jjasteko, sotania jjantzik'ok, eztok?

—Enaixu ridikulue eittera obligeu. Zelan gur'ozu, hemen danak ikusi nauelarik, hor behera sotana tximurtue jazten hastie?

—Ba, nire aldetik galazota daukak Aulestiko kalia sotana barik zapaltzia.

—Nire billur zara, ezta?

—Apur bat bai. Nik uste jjuat gaurko nahikua ein duala mendijjan agertziaz.

—Trankil, Don Emilio! Eztekot Aulestittik bueltan joateko asmorik. Mendittik itzuliko naz.

—Portauko haz, horixe eitxen badok.

Iluntzean, Santa Eufemiako erromerizaleak, erdiak Aulestirantz, erdiak Markinarantz jasten hasi zirenean, mendirik mendi abiatu nintzen neu bakarrik, motxila lepoan eta tristura errebelde bat ariman. Ez al zen absurdua bat-bateko nire bakartasun eremitikoa? Lasterbide bat hartu behar neban, gaua ganera etorriko ez bajatan, baina mendi hareik hatxezkoak eta txarakatsuak direnez gero, nekez aurrera egiten neban eta galdu egin nintzen. Behe urrunean ikusten zen errepidea neukan orientagarri, baina ez zegoen zuzen jasterik. Gautzen hasia zen eta bildurtu egin nintzen. «Ez eurrera ez atzera, otsoak berton jatie besterik etxoat biher! Merezidu bez besterik —pentsetan neban geroago —, sotana potril bet dala-ta hain erreparu txotxoloari jamon eittiarren». Ondoren lasatzen nintzen pentsatuz, motxilan neroana jantzita, ez zela izango ni jaten ausartuko zan piztiarik. Santa Eufemiako zelaian halako ikusmina sortu eben prakak ederto urratuta heldu ziren nonoz Angizera, Aulestitik Gizaburuagara bitarteko auzora. Ez nenkien garbi non nenbilen eta eupada egitea pentsatu neban, aurretik sotana jantziari tirakada batzuk eginda, egun guztiko tximurrak apur bat leuntzeko. Angizen harritu ziren, gaua ondo ilundua baitzen. Etxe aurreko bonbila ixotu zen eta:



—Hara! Berori ez al da Gizaburuko abadie?

—Topau eziñik Gizaburuko bidie!

—Ze pasetan da? Nundik dator ordu honetan?

—Santa Eufemiatik, hortxe goijjen behera.

—Txaraka horretatik? Hor ez dabil basurderik be-ta!

—Eskerrak!

Gizaburuagara beste lau kilometro falta ziren ondino eta, egia esan, —bestela isilean pasatuko nintzen—, auto zaharren batean-edo baten batek eroango ninduen esperantzan egin neban Angizen eupada, auzo haretan okindegi bat baitzegoen, baina ez neban, antza, ulertzeko moduan adierazo, edo inork ez eban eroateko modurik ikusi eta, autualdi batean eguneko pasadizoa egin ondoren, oinez jarraitu behar izan neban. Lehendik nahikoa kilikolo banentorren, beste lau kilometroko errepide gogorrean, hankak apurtuta sartu nintzen abadetxean. Aulestitik etorri banintz, freskoago iritsiko nintzen, baita alegreago be, baina nire asmoa ez zen ondino sotana behin betiko iztea.

## Zahatotik meza

Santa Eufemiako ibilerak hango meza baten barri dakarst. Ez dakit zer motibo zela-ta, gazte talde batek, ez naz gogoratzen nortzuk ez nongoak, egunpasa bat egin nahi eben Santa Eufemian. Orduko Herri Gaztedi edo antzeko talde geldigatxen bat izango zen, mendi-egunaren atxakian, gogoeta edo itzartze lana egin nahi ebana. Neuri eskatu eusten ermitan meza emoteko eta bide batez egunaren animatzaile izateko. Tontorrera heldu ginen, ermita edegi eben eta mezako ogi eta ardao barik aurkitu ginen. Ermitako giltzaren eta baimenaren ardura hartu ebanari ez jakon gai sakramentalak ekarterik bururatu.

—Oin zer eing'u?

—Nik, gure bozue, emong'ot mezie, geure ogijjaz da ardauaz, ondo baderitxozue.

—Meza emoilliek holan baderitxo, guk zer esang'u, ba?

—Eztot uste Jesukristo hasarratuko danik, bere gorputz-odolak bihergiñen ogi-ardauetan ikustiarren.

Zahatotik kalizara ardaoa eta motxilatik altarara ogi zati bat, halantxe burutu zen meza. Zuzenbide kanonikoan edo liturgia ofizialean sakrilegio larria izan zeitekeena besteak baino meza zintzoagoa gertatu zen.

—Eta zeuek zelan hartu zenduen? —galdetu neutson kontatzaileari.

—Batzuri txoka jjaken, baiñe gero danai ondo begitxandu jjakela uste dot.

Meza honen barri oraintsu gogoratu daust batek, guztiz ahaztua baineukan, eta estimatu neutson, zirrara bat sentitzeraino. Ohiko abadetasunetik batzuon abadetasunera zer alde zegoen ikusteko, pasadizo adierazgarria izan daiteke. Ez neutson egintza nabarmenegia eritxiko, nire gomutan ez baiteban lorratz sakonik itxi. Esanaz ganera be ezin dot egun haretako zehaztasun askorik gogora ekarri. Suposatzen dot meza entzuleek be maletako ogitik «jaunartuko» ebela.

Sotanaz egin nituen plazetatik oso argazki gitxi daukat tamalez. Hain barik be, abadetzakorik ez daukat askorik, baina bertsotakoak bitxiak dira. Kanalako meza barrikoaz ganera, Zornotzako Berna auzokoa daukat beste bat, orain urte batzuk eskuratua. Auzo horretan sarri izan naz bertsotan eta behin hango neska batek dinost:

—Gurien badao zure argazki bet, Bernako plazan sotana ta guzti kantetan zauzena.

—Ah, bai? Da oin arte esan barik euki'stezu? Kopijje bat derrigor etara bi'stezu, ze sasoi haretako argazkirik eztekot ijje bape.



## Aizarnan behin

Nire abadetza, guztira be, ez zen luzea izan, kanpoan behintzat, lau urte orduko preso bainengoen. Garai haretan behin bakarrik kantatu neban Gipuzkoan, Aizarnan hain zuzen. Bizkaiko eta Gipuzkoako abadeak, eta neurri batean Euskal Herri guztikoak, orduantxe ginarduen harremon sendoagoak lantzen, eleizbarrutien banatasuna gainditu guran. Loiolan jardunaldi batzuk prestatu genduzen, gogo-jardun antzera, baina gure arreta nagusia, nirea eta beste batzurena behintzat, Euskal Herria, Euskal Eleiza eta euskal abadeen eginbeharrak izango ziren. Egun batzuk izan ziren eta bazkaloste eta beste aisialdietan bertsotan be egiten genduen, bai baitziren antza baino gehiago emoten eutsoen abade batzuk, batez be Jose Agirre izeneko bat, orduan Alkizan abade zegoena. Mikel Atxaga tartean zen, orduan Aizarnan abade zegoena, eta berak proposatu euskun:

—Zergatik ez duzue Aizarnako festetan biok kantatzen?

Ez dakit zein festa izan zen, baina halantxe egin genduen

balkoi batetik Aizarnako plazan. Handik egun batzutara, saio ha (edo zati luze samar bat) «Zeruko Argia»n (ala «Goizargi»n?) argitaratu zela esan eustenean, ikaratu egin nintzen. «Zelan heldu gozak aldizkari bateraino, lagun giroan eta erdi olgetan hasitte?». Lotsa handia emoten eustan, zer bertso modu agertuko ete zen. Gero, aldizkarian bertan irakurri nebazenean, ez jatazen hain eskasak begitandu eta lasaitu ederra hartu neban. Saio haretan bertsolari biok sotanaz gengozen. Aizarnarrek zer irudipen hartu eben ez dakit, baina bazen han abade adineko bat, «erretore zaharra» esaten eutsoena, aldameneko balkoitik errezelo handiz begiratzen euskuna.

## LEHENENGO SAIO PRAKADUNA

Sotanabagetzea aldakuntza ahazkatxa izan bazen, prakadun egin neban lehenengo saioa betiko itsatsia geldituko jatan. «Zatika» deitzen eutsoen taxista bat Gizaburuagara etorri zen, bestela be maiz pasatzen zen handik baina, eta San Kristobal egunean, txoferren jaian, Lekeition kantatzeko gonbita egin eustan. Baietz esan neutson, ez kezka barik. Artean herri txikietan eta auzoetan kantatua izango nintzen, baina Lekeitio pozu handia zen, bertan daneriko arrainak zegozena. Hasi hango abadeakandik (orduan mordoa) eta beste sektore influiente guztietara, banenkien «Gizaburuko abadea» izen kondenatua zela Lekeition, nahizta beste maila batzutan, gazte artean batez be, estimazino handia euki. Bestalde, sotana erantzi barri, hain plaza zelanbait hiritarrean zapla agertzea gordinegi egiten jatan. Baina erronka bat zen, ez hainbeste bertsolari lez, horretan ez baineukan pretentsino handirik, abadetzako jokaera guztiz kontzienteki jareinkorragaitik baino. Bertsolaritzak zapalkuntza frankistaren aurkako eta Euskal Herriaren bizkundearen aldeko ezaugarri bat gehiago eransten eutson nire abadetzari. Eleiz egitura erabat errejimenzale haretan, abade frankistak eta, gehienik be, ekumenistak edo izpiritu unibertsalekoak normal eta nagusi baziren, nik garbi neukan herri zapaldu baten eta eleiza askatzaile baten apustua nire abadetasunaren definizinoan sartzen zela. Bertsolaritzak nire konpromezuaren zentzuna argiagotu, dudabagetu egiten eban. Lekeitioko saioari garrantzi sinboliko handia emoten neutson motibo askogaitik. Ez dakit txoferrei eta batu zen ganerako entzuleria handiari zer inpresino egin eutsen abade «prakadun» bat bertsotan ikusteak, baina niretzat oso barnetasun intentsoko eguna izan zen.

Itxarotekoa zenez, Lekeitioko minluze interesatuek eta sistemapeko sektoreek era guztietako maiseoak zabaldu ebezen ondorengo egunetan, baina banenkien herritar askoren, beharbada gehienen, sinpatia irabazi nebala. Batzuk berariaz eta beste batzuk zeharka, bildur handiko garaia baitzen, poza agertzen eben, baita animua be, esanez: «Segi hortixik, honeri bueltia emon bihar jjako-ta!». Egun haretako bertsolari lagunak Mugartegi eta Arregi izan ziren eta zorionez norbaitek argazkiak etara ebazen. Nire plazako lehenengo argazki prakaduna.

Banenbilen bertsotan, baina neure burua bertsolari amateurtzat neukan. Nahi baino askoz gehiago kostatzen jatan bertso bat taxuz amaitzea. Ez neukan inondik be bertsolari deitzen eutsien izen famatuen sailean sar neintekeen kontzientziarik. Baina famatua nintzen! Abadetzagaitik gehien bat, baina, motibo askotarikoz osotua izan arren, izena bakarra izaten da eta, nahizta neure kautan maila bakotxaren neurriak ondo bereiztu, entzuleen aurrean «Amuriza» nintzen beste barik, hots, «Gizaburuko abadie», edo «Amorotoko abadie», bigarren urtetik aurrera herri hau be neure gain hartu nebanetik. Banenkien nire bertso maila ez zela izenaren araberakoa, baina ez zeukan erremediorik. Kantatzera ninoanean, ezin neban entzuleen espektatiba neure neurrira txikitu. Ezin neban neure izena erregulatu. Bertsolaria nintzen! Zelan edo noz eginda, ostera, bizi guztian dozenerdi saio entzuteke banengoen?

# 2. Itxipeko gaztaroa

## SEMINARIOKO ERRONKA BERTSOTAN

Pare bat urte atzerantz jo beharra dago. Hirugarren urteko teologian nenbilen, karrerako azken aurreko kurtsoan. Hogeta bi urte neukazen eta Gabon aurrea zela uste dot. Teologoen jantokian (lau kurtsoen artean ehunda hogeta hamar bat izango ginen) zeozer ospatzen zen bazkalondo batean. Azken kurtsoko lagun bateri normala baino lehenago ordenatua izateko baimena emon eutsoen, gaisotasun larrian zeukan amak edo aitak abade eginda ikusi ahal zegian. Sukaldeak ohiko arrantxotik zeozer bereziaz gonbidatu ginduzen eta abade barriaren ikaskideek, zoriontzeko, jai xume bat antolatu eben bazkalostean. Ekitaldi haren barruan neuk be bertso batzuk eskeintzea pentsatu neban, isilean. Esan beharrik ez dago han erdera zela ele bakar eta giro orokorra euskeraren kontrakoa, baina talde handi samar bategan euskal kontzientzia oso bizitua zegoen dagoeneko eta prestigiodun erreferentzia bat ginen. Bestalde, ikasleen ohiko kontradikzino senaz ganera, bazen disziplina eta balore tridentinoen aurkako errebeldia sakonago bat, urte gitxitan seminarioetako errejimena, geroz absurduago generitxona, lokatuko ebana. 1963an gagoz eta hamarkada haretan seminarioen egitura tradizionala hankaz gora joango zen.

Teologiako ikasle-lagun eta batez be irakasle-nagusien aurrean, bertso batzuk kantatzera oholtzarantz ninoala, euskal nortasunaren desafio guztia neroan kontzientzian. Formalki inork ezin eban ezer objektatu, lagun bateri abadegintzaren zorion ebanjelikoak emotea besterik ez baitzen, baina, euskeraz eta bertsotan izanik, nire aldartea, pitin bat harroaz ganera, mendekatia be

bazen, entzuleria ofizialistaren abegia euskaltasunaren kontrakoa zela jakinik. Oholtzako laubost mailak igoten niharduela, atzetik nonor somatu neban. Abel Muniategi zen.

—Hik zer ein bi'ok? —itaundu neutson goian.

—Bertsuek kantau —erantzun eban.

—Neu be horretantxe najjatok, ba!

—Alkarregaz kantauko jjuau.

Ez dakit alkarregaz ala alkarren atzean, bakotxak gitxiasko zer kantatu erdi pentsaturik eroango baikenduen, baina badakit biok kantatu genduela eta biok batera jatsi ginela, batzuren txalo beroz eta beste batzuren begirada zehartiz. Abel Muniategi ni baino kurtso bi beheragokoa zen eta, nahizta ezagunak izan, ez geunkan aparteko traturik, halako komunitateetan lagunak gehien bat kurtsoka joaten baitira. Bat beherago edo bat gorago nahiko hur harrapatzen da, baina adin horreitan urte biren tartea handia izaten da eta Abel eta ni ez ginen salbuespenak. Ha bere mahaira eta ni neurera banandu ginenean, zurtz eginda jesarri nintzen. Jantokiko urtekeran itxaron neutson eta, pasilu luzean zehar tropelean ginoazela, esan neutson:

—Gu zelan bixi ixen gozak alkarren ondoan, alkarren barri gaur arte jakin barik?

—Etxakijjat. Oin bajjakijjeuk.

—Zegaittik etxuk alkarraz zozer eitten?

—Ni bertsotako animosuau najjauk errezureko baiño.

## ISILPEKO BERTSO ESKOLA

Hantxe hasi zen nire bertsolaritzako aldikadarik gogotsuen eta xarmantenetakoa. Abel Muniategiren burua, bai etxetik, bai berak landutik, bertsoz eta bertso munduz josita zegoen. Zaletasuna



eta sena be araberakoak zituen eta bertsoak taka-taka osotzen zituen, kanturako belarria justu samarra bazeukan be, baina horrek ez eban ardura. Atoan erabagi genduen alkarregaz lantzen eta praktikatzen hastea. Biontzat oso langintza gogozkoa izanaz ganera, seminarioko itxipenetik eskapu bikaina emongo euskun, baina hortxe zegoen kakoa, zelan eskapatu hango ordutegi eta kontrol zorrotzetik. Komunitate berean bizi izan arren, eguna hamaika ataletan zehazki banandua genduen, klaseak, ikastorduak, mezak, eleizkizunak, errezuak, jatorduak, jolasaldiak... Zorionez, biok be ez geunkan eskrupulu handirik hango eginkizunak saltatzeko, baina zelan eta norantz saltatu, inork ezer ez susmatzeko moduan? Aukerarik egokiena jolasaldiak ziren, baina bai maiteenak be, eta, ahal zela, gurago genduen beste ordu gogaikarri batzuk ostu. Ganera jolasaldietan eta egunez danak zebizen solte eta ez zen hain erreza gure lanerako behar zen diskrezinoa eta bakartasuna lortzea.

Afal ostean ordu lauren bateko solasordua izaten zen, aldraka seminario inguruan atzera-aurrera emongo genduena. Hamarrak lauren gitxiagotan eguneko azken eleizakoa, zazpigarrena, izango zen: kontzientzi azterketa eta zenbait errezu. Ondoren eta isiltasun osoan bakotxa bere logelara. Garbitasunak eta ganerako bakar-zereginak eginik, hamaiketan argi guztiek itxungita egon behar eben. Gehienean gautua baitzen, afaloste haxe zen guretzat ihespiderik onena. Azken eleizakoa ez zen hain kontrolatua eta gure arimek ez eben haren faltagaitik osasunik galduko. Etxeak sotanu ikaragarriak zeukazen, beherengo solairu guztia hartzen ebenak, dana poste, zokondo eta daneriko gelatzar: berogailu galdarak, despentsak, harotzeria, argindarren agintegela, zapategia, trastegiak, erreminta gelak, piano gelak, (oso piano zaharrak), morroizko zerbitzuaren egongelak, erabiltzaile eta garbitzaile jakinik bako komunak eta alperreko gune hautseztatu ugari.

Tabike hareik helburu pentsatuz baino areago bolketera diseinatuak zirudien. «Etxazpi» haretan gauez ez zebilen inor,

edo ez eban ibili behar. Gela huts samar bat, ez handia, begiztatu genduen eta, trasteak baztartu eta aulki bana nondibait jiraturik, hantxe abiatu zen gure lehenengo bertso eskola. Partaide bi bakarrik, baina benetako eskola. Besteak solasaldian, azken eleizakoan edo seminarioko jente mogimentuan eta, beraz, argiak ixotuta zegozenean, sotanuko gela-zoko haretara iristea ez zen gatxa. Behin han sarturik, ez zegoen Jainkoaren ordezkaririk, gu non gengozen asmatuko zeukeenik. Berandu arte egoten ginen eta egotea komeni, danak guztiz erretiratu arte, bidean behar ez zen nonogaz topo ez egiteko. Gauerdi aldera, etxe guztia itxungita zegoen. Orduan sotanu hareitatik hirulau solairu goragoko logeletara igotea arrisku handiko lana zen, inongo argirik iziotu barik egin beharrekoa. Ez zen probablea, baina edozein pasilu bihurgunetan argia izio zeikeen edozein nagusiri nondik zentozela esplikatu behar zeuntson, ordu haretan eta ilunetan?

Sotanu zikinki romantiko haretan gau gozatsuak igaro genduzen. Behin tak atea edegi zen eta maiordomoa (bera be abadea) agertu jakun. Administrazinoaz, hornikuntzaz eta mantenuaz arduratzen zelarik, auskalo nondik eta nora, handixek pasatzea gertatu zen, oinetako isil-isilekin, ostantzean, zaratarik txikienean, argia amatatzen baikenduen. Atepean argitasuna somaturik, amatatzeko asmoz edegi ei eban. Mutila zen, ba, bera, xentimoak alperrik gastetako! Edegi eban eta azkonar bi barruan. Ez dakit nork hartu eban susto handiagoa, guk ala berak. «¿Qué haceis aquí?», itaunduko eban, edo ez dakit «perdón» esanda aldegin eban be. Hak ez zeukan abadekion bizimoduan zerikusi diziplinarrik, baina bihamonean gure prefektu nagusiak, Don Jose Maria Iruretagoienak, dei egin euskun, sotanuan eta ezordu haretan zer egiten genduen kargu hartzeko. Garbi esplikatzea erabagi genduen:

—Begira! Berorrek badaki guk zer zaletasun daukagun. Lehengo eguneko jantokikoa polita izan zen, ezta? Ba, guk hori landu egin gura dogu eta, beste aukerarik aurkitu ezin dogunez



gero, loari kenduta sakrifikatzen gara. Inori ez dautsogu txarrik egiten. Gauza on bat garatzen dihardugu. Zer hoben egiten dogu?

Don Jose Maria Iruretagoiena, gure artean «Iru» esaten geuntsona, disziplina zorrotzaren eta obedientzia itsuaren adiktua zen, baina, euskalduna izanik, baeban hondar sentimental bat, azken batez bihar-etziko eginkizun pastorala duinkiago betetzeko (guk hortik enfokatzen genduen dana) balioko euskun euskera lantzea zuzenki gatxestea galazoten eutsona. Ganera zelan edo halan jarraitzeko erabagi irmoan ikusten ginduzen. Ahalegindu zen gu konbentzitzen, oso diskrezino handiz eta ez hain sutsuki jarrai gengian. Jolasaldietan, pasioetan, bitarte libreetan, baina hitz emon behar geuntson disziplina komunitarioaren barruan moldatuko ginela beti. Guretzat baietz esatea errezena izan zen. Gaueko eleizakoa be saltatzen genduela susmatu izan baleu!

«Iru»gazko pasadizo honen ondoren, seminarioko tokirik solemneena begiztu genduen. «Hementxe bai iñori etxakola bururetuko egon geinttekezanik!». Eraikin erraldoiak hiru parte ondo markatu zeukazen, lau rotonda nabariren artean. Ezkerrean filosofoen komunitatea, eskuman teologoena eta erdian irakasle gelak, nagusien logelak, bibliotekak eta gisako lokal garrantzitsuak. Bigarren solairuan, aurrekaldera emonez, erretorearen («El Señor Rector») bulegoa eta logela zegozen alderdi baten eta bestean gotzainaren egongela eta logela. Atzekaldean igogailua eta honen ezker-eskuman gela txiki bana zegoen, biak hutsik eta, ez dakit zegaitik, giltza barik egoten zirenak. Bigarren solairu hau seminario guztiko printzipala zen duda barik. Bertan erretorea bakarrik bizi zen, orduan Don Santiago Goiri, gotzaina oso gitxitan etorten baitzen, eta zetorrenean, ez zen, ez, disimuluan ibiliko. Seminario guztiaren mobilizazinoa inguratuko eban. Igogailuan nagusiak bakarrik ibil zeitekezen. Abadekiok erabat galazoa genduen tramankulua. Beraz, bigarren solairuko biztanle bakarra erretorea zen. Pasilu handia ezkerretik eskumara (teologiatik filosofiara)

edo alderantziz zeharka zeitekeen, «motibo justifikatua» baldin bazen, baina erdian ez zegoen ezertan geratzerik.

Pentsatu genduen: «Atzeko gela horreitako baten sartzen bagozak, ez gaijjozak Ofezijjo Santuek be topeuko». Sartu ginen eta itzel. Igogailua abiatzen zenean, (burrundada galanta etaraten eban), edo pasiluaren ezker-eskumako ateetako baten hotsa entzuten genduenean, argia itzungiko genduen, arriskua aldendu arte. Kontraleihoak zorrotz itxiko genduzen eta argibesoa ia papereraino okertu, leihoz kanpotik argitasunik soma ez zeiten. Gauero bizpairuk lurrartuko eben solairu hatan, handik Filosofiarantz edo Teologiarantz pasetako. Eguneroko finko-finkoa erretorea zen, oso zehatza bere ordutegian. Minutu batzuk gora behera, beti ordu jakinean eta eztul bardinakaz logelaratuko zen. Igogailutik urteten eta bere gelako atea zabaltzen eta ixten, baita barruan be gero, astrapala kupidabagea etarako eban, batez be erdi mafrunditurik zebilenean. Hak be bera bakarrik zegoela uste! Mahai hots, komun hots, ohe hots, haren lo aurreko urrats guztiak somatzen genduzen pasiluaz bestaldetik, baita zurrunkak be ondoren. «Baleki nun eta zetan gaozen bere musturretan!». Gure erretorea, Gurpide gotzain integrista bezain okerraren menpeko itsua eta zurruna izanaz ganera, ez zen bape euskaltzalea, orduan behintzat. Toki txukunaz eta seguruaz ganera, geure ekitaldia amaitutakoan, sotanutik baino askoz hurrago geunkazen logelak, nik solairu berean hain zuzen.

Denbora batgarrenera, ez naz ondo gogoratzen zegaitik, gela ha erabilteari itxi egin geuntson. Beharbada arriskuren bat agertuko zen, edo gela hareik giltzaz itxiko ebezen, ez baitakit zegaitik egoten ziren zabalik, edo beharbada hirugarren fasera, definitibora, pasatuko ginen, gela haretan ez baitzegoen kantatzerik, berbaroa be neurtu egin behar zen-da. Afal ostean jolasaldira urteten genduen danakaz batera. Hurrengo deia eleizarako zen, eguneko azken otoitzaldira. Gu orduan kanpoan geratuko ginen, beste arimarik geratzen ez zen bakartadean. Artean ondo



gaututa egoten zenez, ez geunkan ezkutatzeko problemarik. Komunitate osoa, apurka-apurka, eleizatik lotaratuko zen, isilik eta meditazinoan, teorian behintzat. Guk behe-oineko pasiluetan zehar eta ganeko lau solairuetako logeletan sotanak eta buruak garbi ikusten genduzen ilunetik argira. Atze parteko geletan, alderik urtenenak okupatzen ebezen leihoen jabeek kanporantz ilunpea besterik ez zeuken eta ilunpe haretan ez eban inortxok egon behar. Beraz, ziur zegozen inork ez zituela ikusten eta guk be kontu handia izango genduen ezer ez adierazoten, baina hamaika gauza zelebre obserbatu genduen, bertsotarako gaia emoten euskuna, batez be bakartasunaren kontzientzian bakotxak bere tximinokeriei emoten eutsenean. Abadegai gazte baten lotara aurreko intimitateak pasarte bitxiak daukaz.

Hamaikak inguruan argiak apurka-apurka amatatuz joango ziren, batzurenak gogoz, beste batzurenak aginduz, han ibilten baitzen gure «Iru» batetik bestera, disziplina gautarra beteazoten. Seminario osoa itzungitakoan, gure indisziplinak nokturnitatearen malezia guztia hartzen eban. Hain zen liluragarria seminarioko izpiritu erabat transgredituaren bibentzia ze, ez genduen ezelako prisarik hartzen erretiratzeko. Gauerdia, ordu batak, ordu biak... bihamoneko meza-meditazinoek ordainduko eben gaueko okerra. Ni horretan harrapatuago nengoen, meza kantatua baldin bazen, koru txikikoa eta gregorianista bainintzen, baina Abel Muniategik, bertsotan hasi ginenetik, ez dot uste mezaren kolorerik ikusi ebanik. Gosarira akuditu beharra zegoen, han bakotxaren sei laguneko mahaian ez baitzegoen falta disimuluan pasatzerik, baina gosaria ederto etorten zen, gaupasa sikua eginda.

Seminarioko bizikeran pentsetarik be ez zegoen ibilera fugatu haren gatxena erretira izaten zen. Zelan sartu isilean bakotxa bere hainbatgarren solairutako logelara, ate guztiak ixten baitziren? Bagenduen tranpa. Eleizak baeban albo-eskilara bat kanpora, sakristauak ondo itxiko ebana, baina baeban baita leiho bat ondoan, kanpotik harrapatzeko modukoa. Hau be, zabalik egon

ezkero, sakristauak hutsik barik itxiko eban. Guk itxita lez lagako genduen, baina kisketa jiratu barik. Ondo begitu ezkero, igar zeitekeen, baina sakristauak ez zeukan hainbesteko maleziarik. Geure orduan kanpotik kontuz-kontuz sakatzen geuntson, leihoa edegiten zen, handik kaperara sartzen ginen eta hemendik, Txit Santuaren argitxoaren laguntasunez, («Perdónanos, Señor!», zetan gabizan badakigu baina) eta zokoetan musturra kontuz luzatuz, onez iritsiko ginen begiak itxita be aurkituko genduen logelara. Baziren ezusteak. Behin, haizeak eraginda edo, leihoa zerbait edegi egingo zen, edo geuk ez genduen ondo lagako, behintzat sakristauak, neure ikaskidea bera, total itxi eban. «Kaben! Oin nundik sartu bi'jjuk?». Ez daukat gogoan zelan eta nondik, baina lortu genduen sotanura sartzea eta nonoz heldu ginen geure logelara, susto galanta pasaturik.

Ez bertsotan, baina gauez kanpoan ibiltea Filosofiako urteetan be probatua neban ederto ikaskide batzukaz. Filosofian (hamazazpitik hogei urtera, nire kasuan), erretea galazota zegoen eta guk seminario atzeko transformadore zahar bati kea etaraten geuntson. Behin kanpoan gelditu ezkero, han be seminarioa loherri bihurtu arte ez zegoen arriskatzerik. Bagenduen geure isilatea, arduradunak itxi ondoren, barriro edegita izten genduena, giltza aldean geratzen baijakon. Bai zigarrotxo gozoak, arautegi orobegiaz haragoko ilokalizazinoan, iluna argia baino infinituago baita! Goizalde batez bagatoz bueltan eta gure ate konplizea itxita! «Erredios! Ointxe gaijjaozek onak!». Seminarioaren atzekaldeko zoko geometriko guztiak (aurrekaldera ez zegoen musturrik deskuidoz be hurreratzerik) miatu genduzen eta ez genduen inondiko sarbiderik aurkitzen. Abadegaien leihoak itxita zegozen. «Zegaittik etxotxuk Ulijjeri deitzen?». Urlia ha gure lagun konfiantzazkoa zen, jastera arriskatu eta zer edo ha edegi zeikiguna. Gure lagunaren leihoa beste dozenaka leihoren artean zegoen, lau solairutatik erdikoan. Beraz, gu gengozen sotanu paretik hirugarren solairura bera be, beheko oina eta lehen solairua jorik. Diharka hasterik ez zegoen. Harkosko fin-finak hartu eta leihora jaurtitzen hasi ginen. «To, to, to! Txarto gabixek! Etxakiguk zein leiho joten dogun eta, apareuko bagendu be, kapaz dok sustoaz baztarrak alarmetako». Geure atearen erditik gorako burdin-sarera behin eta barriro joten genduen eta: «Giltze hortxe jjaok, ba, txarrijje! Kristel bat apurtu bi'jjuk». Kristal lauki txikiak eta lodiak ziren, ostera, eta hareik zarata barik apurtzerik ez zegoen. «Dios! Ointxe galdu gozak!». Larritasunak batzutan argitasuna ekarten baitau, nire lagunak (bi bakarrik ginen) beheko oineko klase batean leiho bati erdi zabalik erreparatu eutson.

—Horraxe igon bi'jjuau.

—Horra igon? Nundik?

—Horman gora.

—Zelan?

—Pentseute.

Lehenengo pentsamentua eskilara lana egingo eban egur bat nondibait jiratzea izan zen. Ideia ez zen txarra, baina igonda gero, ez ginen atzera ha ezkutatzera jatsiko, ezta?

—Bertan itxiko jjuau eta hor konpon!

—Bakik zelako eskandalue armeukò dan seminarijjo guztijjen, hain egur susmagarrijje leijjo kontran atometan deurienien?

—Bijjer goixien lelengo bittartien geuk ezkuteuko jjuau.

—Hori ezin geinkek iñok ikusi barik ein.

—Ba, orduen horman gora igotie besterik etxak.

Seminarioaren hormak sotanuaren paretik lehen oineraino (ez dakit lehen solairuraino be) horma diferentea zeukan, blokelerrotik lerrora hirulau zentimetroko erretentxoa barrurantz zeukala, nondik atzamar puntakaz heltzea bazegoen, baina oso trebea eta indartsua behar zen, gorputza atzamar puntetan goratzeko. Erdia baino gehiago eginda zegoen, azpiko leihoak, sotanukoak, kanpotik burdinazko sarea baitzeukan, eta handik goiko

leihoa eskuar zen.

—Etxak beste erremedijjoik.

—Nik ezin jjoat hortik ijjon!

Nire laguna, ondino abade jarraitzen dauena, ikaskide izan arren, ni baino urte batzuk zaharrago eta ni baino askoz handiago eta indartsuagoa zen. Probatu beharra zegoen. Burdinsarera igonda, nik azpitik oinpeetan euskarri eginez lagundu behar neutson. Iritsi zen leihoko barlasaiari heltzera, baina han gorputz osoa bueltatzea ez zen samurra, nahizta aurretik sotanen enbarazua bizkarrean atzerantz lotu.

—Kontuz! Ointxe jeustie besterik etxuk biher!

Deabruaren inozko zeru konkista inposiblea irudikatzen dodanean, geure buruak seminarioko horman gora ikusten dodaz, gauaren alebosian eta derrigorraren esturan. Nire laguna estudioetan ez zen hain errimea, baina balentria extra-arauzkoetan oroahaltsuaren fama zeukan, gero supermana esango zena, eta lortu eban leihoa gainditzea, hormari zapatakaz arrastada galantak emonda.

—Da oin nik zer?

—Hago trankil, zozomikuoi! Botaidek sotanie gora.

—Hemen harrapetan bagaijjuezak, jeurti bi'ko jjuzek, bai, sotanok betiko.

Bion sotanakaz soka bat eginda, nire bildurrak iragarten eban baino errezago jaso ninduen. Ha zen lasaitua! Handik logeletarako arrisku txikiei ez geuntsen erreparatu be egin. Bihamon goizean gure sotana tximurrek pekatua bistan zeroen, baina nork susmatu behar eban egizko motiborik? Handik hiru urtera, kontatzen hasia nintzen Teologiako kasu bardintsua zelan gainditu genduen ezin dot gogoratu, nire memorian Filosofiako eskapaldi harexek dominatzen baititu antzeko kinka guztiak.

Beste behin, sukaldeetako tximinia handi baten ostetik,



«Iru»ren gorputz erdia eta bere bonete borlagorria behe oineko pasiluan hara-hona pasiatzen-errezatzen ikusten genduen, leiho erraldoien paretik pasatzen zenean. Ha han zebilela, ez zegoen igoterik. Guk ekin geure lanari. Beste argi guztiak itzungi eta gerora be, «Iru»ren bonete borlagorriak han jarraitzen eban pasiluko argitan. Kezkatzen hasi ginen.

—Hori zetan jjabik hor horrenbeste denporan?

—Kantsaukok egune argitxu orduko.

—Da kanpoan gariela susmeu bajjok? Zelatan dabillela emoten jjok.

Suspentsea hain luzatu zen ze, «Iru»ren bonete borlagorri ha ameskatx pasiante baten forman geratu zen gure gogoetan. Gero egunez, bere konprentsinoaren autormen eskertsua bilatuko eban, horretan umeak baino edergurago baitzen:

—¿Qué? ¿Cómo va vuestra actividad particular?

—Con mucha ilusión, padre, dentro de lo poco que se puede.

—Lo hareis en los tiempos libres, ¿verdad?

—¡Qué remedio! No todos los superiores se portarían como usted.

Orduan dirdira bedeinkatu bat zeukan «portatzea» berari aplikatzean, adurra erioten jakon eta ahalegintzen ginen dana bere konfiantzari esker zela adierazoten. Ez zekien, gizajoak, gure ilunpeko ibilera satanikoen barri! Honezkero jakingo dau, beste munduan hemengo kontaduria zorrotza daroela egia bada.

Zer egiten genduen? Zertan zetzan bilerarik txikiena (bikoa) izan daitekeen gure bertso eskola ha? Lehenengo eta behin, nekez izango da gure maiztasuneko bertso eskolarik, egunero aritzen baikinen, baita inoz egunean birritan edo gehiagotan be. Edonoz gengozen erne, arauzko eginkizunak saltatu eta geureari ekiteko. Ekite horretan folioak berba-oinez beteko genduzen, errimatzeko ahalbide bila. Gehienean laukoteak izango ziren, gure ohiko bertsoak

lau puntukoak zirelako. Esaterako, «jatorra, gogorra, motorra, satorra» edo «satsa, mahatsa, baltza, aldatsa». Berba honeik kategoria gramatikalen kontzientzia barik sailkatzen genduzen, orrialde osoak bete arte. Ondino ez ginen konturatzen, ni behintzat, aditz, adjetibo, izen eta abarren balio praktiko ezbardinaz. Holan, adibidez, «satorra» betiko aurrenen itsatsita geldituko jatan, gairik gehienetan berba hori egokitu ezinik ibilten ginelako. Pizti hori nire jatorri ruraleko kontzepturik presenteenetakoa zen, baina ezin izaten neban bertsoan egokitu eta horretan apurtzen neban burua, albora itxi eta beste bat aurkitzen saiatu beharrean, baina honeri be, ez dakit ba, ezinaren autormen edo eritxiko neutson, edo neure sustraiekiko desertzino, satorra nire unibertso kontzeptualean berba garrantzitsua baitzen. Eta da. Oraintxe be nahikoa lorrin egiten daust etxe inguruan. Gure malezia ez zen hainbesteraino ailegetan. Oso gero konturatuko nintzen zein gatxa den, ia ezinezkoa, hasberritan finkatzen diren bizioak zuzentzea. Oraintxe be zeozer —ORRA erriman badatort, SATORRA-k hantxe joko dau tak nire buruan, eguerdia edo iluntzea izan ez arren.

Oin sortak pilotuz ganera (gehienak alperrik nik uste), ofizioko gaiak ipini eta kanta eta kanta jardungo genduen, ez beti bertso guztia jarraian, gura baino eten luzeagoetan aurrera zelan jarraitu asmatu ezinik baino. Ni horretan Abel baino gehiago katigatzen nintzen. Hak hasitako bertsoa zelan-halan amaitzeko nik baino eskrupulu gitxiago edo trebetasun gehiago zeukan. Geroago, abade nintzela egiten genduzen saioetan, sarri esango eustan:

—Hik larrei estutz'ok heure burue. Bertso bateri ze eskatu bi'tsek, ba, neurtu, rimau, zeozer esan da aurrera baino? Etorrik'ok aukerie batien ez bada bestien, heuk nahi duana esateko.

Eta halantxe, gaiak ipinita, gogaitu arte ekiten geuntson. Gero buruz genkizen ehundaka bertsoen komentarioak be egingo genduzen, autuak zekarzenak kantatuz, ez hainbeste ezetako metodo lez, horixe gustatzen jakulako baino. Eta bertsoen ingu-



ruan geure euskal munduko beste hamaika kontu jorratuko genduen, pertsonaiak, pasadizoak, halango eta bestelango idazleak, gai politikoak be bai, orduan seminarioan azpitik, baina oso bizi zebizenak. Karreran aurrera ginoazenak eta, beraz, kultura orokorrean nahikoa eskolatuak izan arren, gure bertso eskola gautarra informala eta primarioa zen. Oin laukoteak begien bistan euki arren, ez jakun burutik pasetan hareikaz zuzenean bertso bat egitea intentetarik, gero lau oinak emonda esango jakon modalitatean. Errimaren garrantziaz ohartu ginen, klabe handi bat izan zeitekeela susmatu genduen, baina ez genkien forma emoten. Gurea «ekin eta jarrai» zen. Ilusinoaren metodoa. Gero lagun bat edo beste gehitzen jakun aldizka, batez be Anjel Ugarteburu berriatuarra eta Jose Mari Irazola elorriotarra. Honeik entzule etorri ohi ziren, inoz kantari be bai, gaiak jarten eta balorapenak emoten euskuezen eta bertsoaren xarman eta euskeraren kontzientzian irla zoragarriak sortzen genduzen, lantzean horma zahar baten kontra. Behin Irazola horrek Abeli puntu hau jarri eutson:

*Kukuak jazten ditu*
*kukuaren prakak*

Abelek erantzun:

*Haietan sartutzeko* *hantxe ditu hankak.*

Hain barregura handia emon euskun ze, hortxe amaitu zen dena. Gero ganeko egunetan, hamaika bider galdetuko eben Irazolak eta Ugarteburuk, ondino barreka:

—Zer? Kukuek topau ete jjozak, ba, praketan sartzeko hankak?

Neuk be orduantxe kantatuko neban Abelek hain gogoan hartu eban «Iru»ri buruzko bertsoa. Don Jose Maria Iruretagoiena gure nagusietako bat zen eta jagole arriskutsua. Gerran ezker eskuko atzamar bi galdu ebazen, beraz, hiru gelditzen. Erretoror-

dea zen eta, beraz, Bizkaiko hierarkian guretzat hirugarrena: gotzaina, erretorea, erretorordea. Eta «Iru» esaten geuntson. Orduan euskeraz hatxerik ezagutzen ez genduenez, holakoa izan zen bertsoa:

*Bere izena Iru dauka ta*
*iru atzamar geldítu*
*Bizkaian barriz irugarrentzat*
*bera dabe elejitu.*
*Orra or bada iru iruko*
*Iru bategan kabitu*
*milagro ez bada arrautzak ere*
*irukotxak bear ditu.*

Urtean behin «afari hotza» izenekoa egiten zen bai Filosofiako, bai Teologiako jantokian. Menu berezia jarten euskuen, ardao eta guzti, ez beste mundukoa, baina zeozer diferentea (eta asetzeko beste) nahikoa zen orduan, gure haginak emozionatzeko. Afalostea ikasleek banan edo taldeka prestaturiko sorpresaz betea izaten zen, parodiak, txisteak, kantak, antzerki txikiak... edozer, baina dana umorezkoa eta ez gitxitan satirikoa, seminarioko bizimoduaz eta pertsonaiez. Afari haretan nagusi guztiak han izango ziren gugaz afaltzen, erretoreagandik azkeneraino, eta jakintzat joten zen edozer onartzeko prest egon behar ebela eta abadegaiok saiatzen ginen gau bateko adierazpen askatasunari etekina etaraten. Dana erderaz, jakina. Abel Muniategik eta biok saio bat egitea pentsatu genduen komunitate osoaren eta batez be nagusi guztien aurrean, gehienak ez baitziren bape harikoak. Bai harro kantatu be guk! Gogoan dot bederatziko labur batzuk puntura lez kantatu genduzela eta gero beste zenbait bertso zortziko handian, binango era ohikoan. Abadegaien artean euskeragazko begi onak eta begi txarrak nahikoa argi banandurik zegozen, indiferenteak edo ondino ezetara itzartu bakoak be baziren baina. Euskeraz zekienen proportzinoa ez zen ehuneko hogeta



hamarretik gora izango. Aldekoek poz nabarmena erakusten eben, baina egun haretan zuriek, gorriek zein baltzek, danek jo behar eben txalo eta a zer oilar parea jatsi ginen oholtzatik, geure gangarrok ustez ondo erakutsita.

Ikasurtearen azken aldera, azterketen sasoiak arrapalada larriak eragiten ebazen bagilean, baina guk ez geuntson bertsoketari itxiko. Hilaren erdi inguruan, seminarioan har neikeen albisterik okerrenetakoa heldu jatan, Abelek esan eustanean:

—Hi, Jabier! Gauza bat esan bi'uat. Uste jjuat lagun legiek hiri esatie eskatze'stela. Abadetzie itxi ein bi'jjuat.

—Beste barik? —Ez nenkien zer esan, zeharo zurturik.

—Gehijjau enaijjatok hona.

—Noz pentseu'ok hori?

—Aspalditxutik jjeukat erabagijje hartute, baiña eneuan desgusturik emon gure.

—Da gure bertsogintzie?

—Datorren urtien bakarrik ekin biko'tsek.

—Hau dok lastimie!

Beste urtebetean jarrai zegian arrazoiak iradokitzen be hasi nintzen, baina laster etsi behar izan neban. Kasu haretan ni nintzen gerakin errukarria. Ha bazihan! Nik abadegintza oso hur neukan, hurrengo urtean bertan, eta ez zen konbentziturik ez nengoelako, sinesten baineban nik uste neban lako abadeek on handia egin zeikiela Euskal Herrian alde guztietatik, baina Abelen erabagiak inbidiatik hurreko tristuran itzi ninduen. Nire gogoak ezin eban sasoiaren kanpomina ordain atseginez ordeztu.

## Gaztelaniaz, latinez eta grekoz

Pare bat urte urte lehenago, nire lehenengo bertsoak gaztelaniaz izango ziren, bederatzi puntuko laburrean eurak. Bertsoen gaitik,

teologiako lehenengo urtea izango zen, «Ecclesia» eta «Sagrada Escritura» suieten irakasleak agiri baitira. Ikasturtearen azkenerantz, arestian aitatutako «afari hotza» izeneko jai berezia izaten zen, non bazen halako adierazpen askatasun konsentitu bat, abadegaiok geure puntadak eta asaskuak entzunazoteko baliatzen genduena. Dana umore klabean suposatzen zen egintza komunitario haretaz nagusiek ez zeuken hasarrerik edo mendekurik hartzerik. Geurez ezarten genduen badaezpadako autozentsuraren barruan, batez be hirurogei ingurutik gora, nahikoa kritika lotsabagea garatu zen.

Erderazko bertsook kantatzea pentsatu nebanean, hogeta bat urte egin barri nintzen. Suiet bi horreixek izan ziren ikasturteko gogorrenak, batez be «Ecclesia», zeinaren irakasleak apuntez kargatzera behartzen ginduzen, geuk hartu eta geuk multikopista konbatiente batean inprimatu beharrekoak. Azterketak amaituak ziren, estuasunak zelanbait pasatuak eta zorroztasunari korritzen izteko moduan gengozen. Hamaika edo hamabi bertso egin nituen eta sei honeixek baino ezin izan dodaz gogoratu, eurok erdizka batzuk. Hainbeste urteren buruan ez da gitxi, baina badaukat pena, sorta osoa ez gorde izana. Gogoan daukat espetxean, oraindik gomutak hurrago nebazela, zelan ahalegindu nintzen bertso hareik gogora ekarten eta uste dot gehienbat berreskuratu eta idatzi nebazela, baina nork jakin paper ha nora aldendu zen. Ez dakit egun berean ala beste batean, latinez eta grekoz be kantatu nebazen bederatzi puntuko batzuk, baina bertso honein lorratzik be ez jat geratu. Gaztelaniazko sortaren tonua, sasoi haretako seminarioen rigorismoan, nahikoa gordina eta gangarra da. Horrek esan gura dau batzuren errebeldi sena nahikoa aurreratua zela.

Tonu orokorraz ganera, erabilten diren berba batzuk nabarmen samarrak dira hango moralitaterako: «prostitución», «casta Maritornes», «partos forzosos», «tricornes» etab. Ez jat ahaztuko handik egun batzutara mojen eta neskameen (auskalo nondik ekarritako neskatxoen) aurrean be kantatu nebazenekoa. Noizean filme inofentsibo bat emoten euskuen (behin damutu jaken Grace Kellyren bat ipintea, komunitate guztia zorabiatu ebana) eta han gengozen danok aretoa betean. Atzeko goi-oilategian mojak eta neskameak jesarten ziren, guztiz bereiz, hareik be zeozer ikusi guran. Proiekzinoa hasi eta laster eten egin zen, sarri gertatzen zen aberia edo zentsurazko mozketa bategaitik. Gehienean bizkor konpontzen zen akatsa, baina egun haretan luzatzen eta luzatzen zihoan eta, denpora pasagarritzat, txiste kontalariak eta halako espontaneoak eskatu ebezen, filmea barriro abiatu arte. Aukera aparta ikusi neban, bertsook barriro kantatzeko. Ganera ez dakit, halako gehienetan gertatzen zenez, komunitate biak, teologoena eta filosofoena, batera ez gengozen be. Kasu horretan filosofoek lehenengoz entzungo eben eta arreta txundikorragoz, gazteagoak baitziren. Garbi daukadana da mojen eta neskameen komunitatea han zegoela goiko oilategiko erdi-iluntasunean eta, hasiz batera, «este cuento que no es de la prostitusión» lako esakerak eta ondoren nagusien izenak halan zirikatzen entzutea nahikoa eskandalu gertatu zen. Gero nagusi batek edo bestek atentzinoa emon eusten. Nik: «¡Pero si los canté ante ustedes en la cena fría y todos aplaudieron!». Hori egia zen, baina suposatzen zen afari hotzeko permisioa ez zela kontestutik haragotzekoa eta ondo gogoan daukat zirkunstantziek faboratzen eben inozotasun osoko plantan (aberia bat konpondu arteko prestasun karitatiboa), nahikoa malezia kontzientea erabili nebala.

Azkenik, bertso honeik erdal metrikari jaramon gitxi egiten dautsoe. Silabak batzutan euskal erara ebagiten dira, (gaztelaniazko «gra-cias», «u-ni-cor-nio» = «gra-si-as», «u-ni-cor-ni-o» eta abar), gaztelaniaz beharreko sinalefak ez dira beti errespetatzen, erriman hitz oxitonoari (azentua azken silaban daroanari) silaba bat gehiago kontatzeko araua ez da betetzen. Esaterako, «cons-ti-tu-ción» oina bost silabakotzat jo behar da. Eta abar. Bederatzi puntuko neurria ez da beti errespetatzen, batzutan luzeago egiten baita, bosgarrenaren bigarren partean lez. Erriman

be oso gogoan daukat parera ez zetorren «al Abbas Joaquim» hori egokitu guran zenbat ahalegin egin neban. Ez neban konponbiderik aurkitu, baina horixe esan gura neban eta dagoen moduan geratu zen. Bertso honeitako arau-haustea garai eta adin haretako transgresino gogoagaz bat zetorren.

1)

*Escuchemos, señores*
*de la constitusión*
*este cuento que no es de*
*la prostitusión.*
*Don Joaquin y Ubieta*
*¡ene qué diversión!*
*son los protagonistas*
*de esta bella funsión.*
*Despues de una sesión*
*de larga discusión*
*dimos la dezisión*
*en común votasión*
*de conferirles gratis*
*la Extrema Unsión.*



2)

*Don Joaquin y Ubieta*
*ambos belicosos*
*no sé cómo nos han*
*dejado ilesos.*
*Hasta la multicopia*
*en partos fortzosos*
*la pobre está de baja*
*llena de diviesos.*
*¿Qué se creen ésos*
*calibrados mosos*
*per se traviesos*
*per accidens sosos?*
*¡Nos han dejado derro-*
*tados los sesos!*

3)

*Las dosientas cuarenta*
*y onse folias*
*nos las hemos fagotisao*
*en seis días.*
*Hay valientes que dicen:*
*¡Vaya tonterías!*
*Pues, a poco nos meten*
*las postrimerías.*
*¡Vaya lata nos diste*
*oh, buen Jeremías*
*tanto el profeta como*
*el de las Galias!*
*Sin vanaglorias*
*ni melancolías*
*para da grasias*
*de tantas glorias*
*resemos con fervor*
*tres avemarías.*



4)

*¿Cómo habremos salido*
*vivos e incólumes*
*de días tan fieros y*
*noches insomnes?*
*!Oh, tú, la siempre enjuta*
*casta Maritornes!*
*Ten piedad de estos pobres*
*bípedos implumes.*
.................
.................
*no dejes impunes*
*a esos dos tricornes*
*por amor de tu*
*Lizaurillo de Tormes.*

5)

*Una virtud sí tuvo*
*tanto infortunio*
*que ya no tememos al*
*unicornio.*
*Desde el pasado octubre*
*hasta este junio*
....................
....................

6)

*¡Oh, Virgen y Reina de*
*nuestra galaxia!*
*¿Quién nos ha propinado*
*tal desgrasia?*
..................
..................
*Santa Ecclesia*
*fuente de grasia*
*néctar y ambrosía*
*de la cleresía.*
*señor polisía*
*pido justisia*
*al Abbas Joaquim*
*en la Caucasia*
*téngalo sujeto hasta*
*la Parusía.*

**Don Joaquin:** Don Joaquín Perea, «Ecclesia»-ko irakaslea, geroago «Abbas Joaquim» lez aitatzen eta bertso honeitan agertzen dena, emon euskuzen buruhauste guztien ordainez. **Ubieta:** Don Jose Angel Ubieta, gero elizbarrutiko bikario izango zena. **Jeremías:** Itun zaharreko profeta nagusietako bat eta izen bereko teologo frantziar bat. **Tricornes:** Izatez gure nagusiek lau adarreko bonetea erabilten eben, erdian borla gorri bategaz. Abadegaiok borla bakoa, badaezpadan be. **Lizaurillo de Tormes:** Lazarillo de Tormes-en deformazinoa. Gure kurtsoan bazen Lizaur abizeneko abadegai bat, seminarioko zeharbide guztietan ezin trebeagoa, baina ikasteko zaletasuna tamainuan zeukana. **Parusia:** garaien azkenean gertatuko dela suposatzen den Jesukristoren etorrera loriosa.



## SEMINARIOTIK BEDIAKO PLAZARA

Atzera urte bi gorantz eginda, kostatu jatan Abel Muniategik seminariotik alde egitearen nahibagea menperatzen, baina geure bertso eskolari amai triunfala emon behar geuntson. San Joan bezperan oporretara ginoazen eta San Joanak edonon ziren jai, Bedian adibidez, non nik arreba bat bizi neban eta dodan. Herri horretako tabernetan lehenago be inoz bertso batzuk kantatua nintzen. Abeli esan neutson:

—Zegaittik etxuk San Joan egunien Bedian kantetan?

—Nigaitxik bai.

Halantxe egin genduen. Oporretan ginoazen, ha betiko, ni itzultzeko, baina joan ginoazen, sorbaldak maletaz eta gogoa pozez kargaturik. Oraintxe be hamaika aldiz ames egiten dot seminariotik etxerakoaz. Hartu beharreko eta itxi beharreko hainbeste gauza (erropa, liburu, oinetako, jolasgailu) maletan sartzen edo bueltarako behar den tokian gordetzen nabilela, Derioko geralekuan orduoroko trenak erreskan alde egiten ikusten dodaz. Goizean abiatzekotan, azkenean bazkaltzen geratzen naz, baina pozik. Arratsaldean be, gauza guztiak atondu aurretik, trenek erreskan joaten jarraitzen

dabe, ilundeak harrapatzen nau, inoz azken trenak eskapatzen daust eta gau bat gehiago egin behar seminarioan, baina pozez saltoka, etxerabidea gozatzen ari bainaz. Nire bizitzako bidaiarik zoragarriena seminariotik etxeranzkoa izan da, joatenjoaten, bidea luzatzea atseginik handiena luzatzea zela. Behin etxera iritsitakoan, atzera-kontua hasiko zen, egunik egun, abiadura azeleratuan, itzulera inebitablea ekarriko ebana. Hau zer zen esan beharrik ez dago, baten batek tristuraren lurpebideak arakatu gura ez badauz.

San Joan bezpera hatan Bediara jo genduen zuzen eta, arrebarenean lo eginda, bihamonean larrosak baizen fresko (negu-

tegikoak baina) agertu ginen plazan, guri-guri, meza nagusian kristinau guztiak «nortzuk dire mutil polit horrik» ahapeka jarri ondoren, nire pentsamentuan bederen. Zeri eta zelan ekingo geuntson ez dakit, baina guretzat exitua izan zen, gero tabernarik taberna jarraituko genduela. «Botaiok honeri andreak domineute bizi dala, botaiok taberneruen geugaitik aberastu dala, botaiok tabernereari geuberditik gora gugaz hasarratzea arpelik dala, botaiok honeri ia korneteak ezkontako martxarik ezteuen yoten». Eta holantxe, ez bertsoa osotzea kosta barik, niri behintzat.

—Hi, Abel! Hik oin neskakana hurreratzie libre dekok.

—Itxaik apur baten! Pentsetako astijje bi'jjuat.

—Da eurek hurreratzen bajjazak?

—Eztitxuk atrebiduko.

—Baia atrebidu leittikezak!

—Orduen ikusi ein biher, eskuek poltsikuen sartute.

## ETXANOKO ANDRAMARIAK

Uda haretan Etxanoko Andra Marietan be kantatu genduen biok, agorrilaren hamabostean. Meza nagusi kantatuan, Ave Maria bereziren bategaz, neure oilarkeritxoak egin ondoren (zintzoak, baina oilarkeriak), Txominen balkoitik neure herriko plazara kantatzeak zirrara mundutarragoa zekarren. Eleizako korutik ginarduela, ikusi ezin ginduezen eta intentatzea pekatu izango eben buru makurrek plazan aurrez eta irribarrez begitzen euskuen. Eta eskuek txalo joten eben, ahurrak betean. Ez ni harei ez eurak niri berbetan ausartzen ez ziren neskek be (nire umetako «nobiak» eta geroagoko beste amesgai baltzeranak tartean ziren) txalo azeleratuak joten ebezen. Ni laster abade egiteko eta Abel abadetzari agur egin barri, ez zen entzuleen gustoko gairik falta. Abelek nire abadetza dudan jarriko eban eta nik haren mutiltasun



libratua salgai ipiniko neban. Gaia eta pertsonaiak bertan izanik, sekulako arrakasta izan genduen, edo niri behintzat inpresino horixe geratu jatan. Sasoi afantsu haretako egintzei buruz, oso gatx egiten jat bereiztea benetan gertatu zena eta gertatua izan zeiten desio nebana. Uda haretan ez dakit beste inon kantatuko genduen.

Irailaren azkenean ni barriro seminariora eta bera Deustuko Unibertsitatera, Bilboko Alde Zaharreko kale-ostatu ilun batean astea pasatuko ebalarik, bere anaiagaz batera. Iluntasun hari osteko bizitza amesgarri baten berde sundea hartzen neutson, hezetasun soila be izan zeitekeen baina. Seminariora itzulita, lagunentzat eta nagusientzat bertsolari nintzen eta urtean zehar komunitateko jai edo ekitaldi berezietan bertsoak kantatuko nebazen, baina aurreko urteko bertso eskola ilusinotsu ha falta zen. Egiten nebana bakarrik egingo neban eta bakarrik oso gauza gitxi egiten nenkien, Bilboko Verdes Liburudendan jiratzen nituen bertso liburuak irakurri eta berrirakurri besterik. Seminarioko bizimodu arautuan atzera-aurrera, eta zeozeren edo nonoren zain egunero pilotzen zen minutu mordoan, teorian isilik eta errezuan egin beharrekoan, baita klase eta eleizkizun saihesgatxetan, hamaika bertso kantetan neban mentalki, inoz aldi berean errosario garauak hatz artean trebeki pasatuz. Bertso bakotxeko garaua aurrera, Agur Mariak eta Santa Mariak bailiran. Barrua askatua denean, era asko dagoz kanpoa engainatzeko. Hatara jarririk, seminarioko bizitzak egunean ordu libre asko emon zeikeen. Inoz neure buruari erronka egiten neutson:

—Ia geur, egun guztijjen ziher, dakittezen bertso guztijjek kantetie lortz'oten.

Ez neban sekula lortu. Gauean oheratu eta amaitu arteko asmo irmoan jarraituko neban, baina «Marijje Bekanikok» (Maria Bekainekok) ezabatzen eban erronka eta gauza jakina da amesa ez dela gauzak ordenan eroateko egina.

## LAUROETAKO POZAK

Seminario garaian oso aparteko xarmaz aitatu behar ditut Loiuko Lauroeta auzora Luzio Aurrekoetxeak eta biok azken hiru urteetan domekaro egiten genduzen joanetorriak, hango umeei dotrina emotera eta arrastiko eleizkizuna (errosarioa, maiatzeko lorak, garizumako kuruzpidea, San Joseren zazpi atsekabe-atseginak eta abar) ofiziatzera. Eleizkizun honetara auzoko umeak, andrak eta neskak etorten ziren eta gu harein «abadetxoak» ginen. Urtekera hareik kanporanzko oasis bat ziren guretzat, batez be azken urte bietan nire lagunak etxeko motorra bertan eukiteko eta erabilteko baimena lortu ebanean. Anaia Ameriketara joan jakola-ta, domeketako geure «eginkizun pastoralerako» ederto etorriko jakula-ta, ostantzean Seminariotik Laurotara ia pare bat orduko bidea baikenduen, halan ibili ginen bolada luzean, geure sotanabekak soinean. Eskubide ha beste abadegai guztien bekaizgarri zen eta ondino ez dot ulertzen zelan lortu genduen gaztetasun irrikatsu haretan hain diferentzia nabarmena ezarten eban pribilejioa. Domekako bazkalostean, beste komunitate guztiak han tirri-tarra pasiatzen itzita, Vespa elegante baten irrintza ganean abiatzen ginenean, Kennedy Lurmusturretik baino harroago urrunduko ginen, sotana barrenak pozaren haizeari emonda.

Laurotan bazen taberna bat eta han sartzeko askatasuna geure kontura hartuko genduen, baita inoz beste ibilera batzuk egiteko be Mungialdetik (Laukiz, Gatika, Gamiz, Fruiz) eta asagotik. Behin Markinako Iruzubietaraino heldu ginen. Bueltan afalordurako egon ezkero, gatxa zen gure Vesparen lorratzari jarraitzea, istripuren bat-edo gertatu ezik. Hortxe ginen bildur, baina zortea lagun izan genduen, ez geuk bilatu barik, noski. Afarira inoz huts egingo genduen, baina begeunkazen geure koartadak. Azken batez, motorra aberiatuta, komediak egin behar izan genduzelako atxakia be han zegoen. Ez genduen guzurrik asmatu beharrik izan. Normalean gure Laurotako ibilera zintzoa izaten zen, bera baitzen guretzat nahikoa eskapu, eguerdi osteko hirurak aldetik gaueko bederatzirak arte.



Bazen Loiun Kastresana izeneko bertsolari bat, bertsotan polito egiten ebana eta kantetako nagirik sekula erakusten ez ebana. Nik baneban haren entzutea eta ezagutu egin gura neban. Behin lortu genduen lagunarte batean aurkitzea eta nik be agertuko neutson halako zerbaiten izatea edo izan nahia. Burua erakustea tentagarri da, konpromisoak ez baletoz, eta horixe gertatzen jatan beti. Nire lagun Luziok arin botako eban:

—Hau be bertsolarijje da!

—Bai zera! —desenkusatuko nintzen ni —. Ixen gurie bakarrik.

Eta halantxe, ez eta bai eta bai eta ez, Loiuko lokal batean, (ez naz gogoratzen zer zen garbi), Don Pantaleon parrokoa bertan zegoela, Kastresanagaz saio bat egin neban, larritasun galantean. Harrezkero beste behin edo behin be egingo genduen. Laurotan zabaldu zan, edo zabal zeiten bidea egin neban, bertsolaria nintzela eta, jenteak baldin bazinoan, ez zegoen izateaz beste erremediorik. Halan, inoz auzoko tabernan eskatuko eusten eta beti ezin izan neban albo egin. Beraz, herrian be (Etxano, Gorozika, Bedia eta Lauroeta, horreixek ziren nire orduko mundu zabala) bertsolaria nintzen, artean inon bertso saiorik entzun barik.

Beste behingoa be ondo gogoan daukat. Artzain Onaren egunean Seminarioko Schola Cantoruma Derioko parrokiara joaten zen, meza nagusia kantatzera, hango parroko Don Tomasen omenez. Don Tomas hau oso maitea genduen eta gero abadetzan estimu handia izan neutson. Ahots heldu eta tiple, hirurogeita hamar bat laguneko scholak Derioko eleiza dardaratu egiten genduen, batez be azkenengo Händelen Alleluyan, eta Don Tomas bihozberak ezin izaten eban malkorik gorde. Abadegaiontzat urtekera triunfal ha irrikaz itxarona izaten zen, batez be ostean, herritarrakaz nahastean, guretzat oso berezia zen hamaiketakora gon-

bidatzen baikinduezen. Seminarioko austeritatearentzat gauza gitxi behar zen, guretzat oso berezia izateko. Giro haretan dana begi nintzela, nonori gogoratu jakon bertso bat kanta nengiala, Don Tomas zorionduz. Begiok laster batu jatazen, bai! Inoz holakoetan sentitu ohi dodan taupada zaku barruko erbi batena lakotzat konparatu izan dot, baina egun haretakoa zaldi-ihutia izan zela uste dot. Scholan seminarioko komunitate guztiak zegozen ordezkatuak, ahots grabeetan teologo eta filosofoak eta tipleetan seminario txiki guztia. Beraz, neure komunitateren ez ezik, seminario guztiko ordezkaritzaren aurrez nengoen. Eta ganera Derioko herritarrak bertan, andrak eta neskak artean zirela. Scholako zuzendaria, musikari ona bezain prefektu zorrotza, (gure nagusi edo jagoleak disziplinako «prefektuak» deitzen ziren), ez geunkan euskeraren aldekotzat sailkatua, baina esan eutsoen:

—¡Padre! Le hemos pedido a Amuriza que cante un verso en honor de Don Tomás.

—¡Claro! Don Tomás bien se lo merece —baieztu eban berak.

—¡Venga, Amuriza! ¡Anímate! —hasi ziren lagunak.

Scholako zuzendariak amoltsu erreakzionatu eban, barrutik ez dakit zer sentituko eban baina. Don Tomasen begietan, bertso kontua entzun ebanean, beste argitasun bat zabaldu zen. Haren barruan benetako euskal sentimentua eta zapalkuntzaren mina zegoen eta gune itxiki erdaldun eta prestigiatu haretan (Seminarioko schola bat ez zen baserri bateko askaurrea) «bertsolari bat» entzun ahal izateak Händelen Alleluyak baino gehiago hunkituko eban. Kostata eta dardaraz, bota nebazen bertso bat edo bi, zelako-halakoak,Don Tomasen malkoak ikusi nebazen, jenteak txalo ugari jo eban, unearen hunkigarritasunak eraginda areago, eta fenomeno bat lez geratu nintzen. Don Tomas, egun haretako omendua eta abadegai guztion miresgaia, hurreratu eta bera niganako miresmenetik euskeraz hasi jata-



nean, nire baitako zaldi izutua bere figura lerden eta exhibentean harrotu zen.

## AUZO SARIKETAK

Lehenago, hogei bat urte nituela, sariketa txiki bitan kantatu neban Etxanon. Berez huskeriak zirenak niretzat galaxiak gertatu ziren. Agorrilaren azken domekan, San Bartolome errepetezinoan, Autzaganeko jaiak ziren, non gure etxeko gonbidatu eguna ospatzen genduen. Urte batez, goizean, oinezko lasterketen ondoren, bertsolari sariketa bat antolatu eben, neu auzoko izatea baliatuz. Gure aita tartean zela, ez zen afanik eta soinurik faltako. Partaidetza Etxanora eta Gorozikara mugatu zen. Gorozikatik «kontrario» bi aurkeztu ziren, bata «Txikito» esaten eutsoena. Ez dot uste gairik izan zenik, bakotxak ahal ebana kantatu genduen eta neu izentatu ninduen irabazle. Nor egingo eben, ba, «auzoko estudiantea» bainintzen? Kopa merke bat eta hamar hogerleko emon eustezen eta ni pospolina baino pozago. Txapela be bazen. Txikito gizon heldua zen, tabernetan famatua eta bromosoa, eta hareri apur bat eder egitearren edo pozik bialtzearren edo adarra jotearren, nik al dakit, batzuk pentsatu eben:

—Hi! Lelengo sarijje heurie ixen dok, baia Txikitori berak irebazi deuela esan bi'txuk.

Halan zabaltzen hasi ziren Autzaganeko taberna bietan, nik be palutik jarraitu neban eta egun haretan, gorozikarrek burua beroturik, dudan joan zen Txikitok azkenean sinestu egin eban berak irabazi ebala. Handik hamabost egunera Gorozikako jaietan, iraileko Andra Marietan, Txikito han zebilen Autzagane aldeko guztiei desafioka. Inork ez geuntson ukatzen berak irabazi ebanik, are gitxiago Gorozikan, bere herrian gengozela, baina hak autormena barik sariak gura ebazen eta horreik neuk be ez neukazen emote-

ko, dirua batez be. Autzaganeko sariketak oste luzea ekarri eban.

Hurrengo urteko udan Etxanoko jaietan be, agorrileko Andra Marietan, antzeko sariketa bat antolatzea pentsatu eben. Partaidetza zabal itxi zen, gura ebana etorteko moduan, eta Muxikako Ariatzatik agertu ziren bi, Iturri Bigarrena eta izenik gogoratzen ez dodan beste mutil baltz bat, begira errespetoa emoten ebana. Honeik ibiliagoak eta trebeagoak ziren. Etxanoko sariketa formalismo gehiagoz antolatu zen. Hirukote bat jarri eben epaimahai eta gogoan daukat Txomin Etxano zela aurkezle eta epaile buru. Gairen bat be jarri euskuela uste dot eta azkenean lehenengo saria (ez naz gogoratzen zer) niri emotea erabagi eben. Ariatzarrak nahikoa hasarre joan ei ziren eta seguruenik arrazoia eroango eben, ni baino bertsolari hobea izateko, gauza handirik ez baitzen behar, baina sariak bertan itzi behar izan ebezen. Badakizu, ba, herrikoa eta estudiantea bainintzen, eta hori bai, orduan sasoi beteko kantaria nengoen, seminarioko schola cantorum, koru txiki, gregorianista eta musikagune guztietan nenbilena. Etxanoko korutik be solo ugari kantatu ohi neban, batez be egun handietan.

Ustezko anpulu lorios haretan prakak betean nenbilen arren, ez nintzen ezer ikusgarria. Nire mundua oso txikia eta isolatua zen. Uda guztian egun bereziren bat edo beste kenduta, Etxanotik Torreburura eta Torreburutik Etxanora bizi nintzen, ordu erdiko bidean, mendian gora eta behera. Torreburun etxe bi besterik ez ginen, eurak aparte samar, gorago ez zegoen ezer eta mundua handik urrun eta behean, ia hankapean, ikusten neban, imajinatu areago. Etxano, barriz, dozenerdi bat etxeko eleizaldea zen, bere eleiza, eskola eta kanposantuagaz. Haxe zen nire ohiko gizartea. Mundua niretzat noizbehinka jasten nintzen Zornotzatik harantz zegoen.

## ABENDU KANTARI

Hain zuzen, Zornotzan gertatuko zen nire abadegai aroko arrakastarik harrogarriena, beharbada ez hainbeste jardunagatik beragaitik, Zornotzagaitik baino, hau orduan be herri handia eta kaletsua zen-da. Mundua eta munduaren ataria. Niretzat Torreburutik Zornotzara hemendik Bilbora baino jauzi handiagoa zegoen. Bilbo ez zen Zornotza handiago bat besterik. Urte batez, Etxanoko mutil taldeak abendua kantetan urtetea pentsatu eban eta neuk hartu neban taldearen gidaritza. Kontzezino egunerako, Abenduaren zortzian, Seminarioaren Eguna zela bide, herririk herri etorten ginen (bezpera iluntzean etorri eta bihamon goizean heurt barriro), geure sotana-bekakaz, niri gitxien gustatzen jatan lan bat egitera: dirua batzera. Eskerrak niri, mendikoa nintzelako, beti Etxano izentatzen eustela, ezagutzen neban eta ninduen herria. Nire etxanotar beste lagunak Zornotza kubritu behar izaten eban, han abadegai gitxi baitzegoen. Zornotzara eskean joan behar izan baneu, lotsaz gaisotuko nintzatekeen. Etxanora pozarren etorten nintzen. Bezperan gure etxean txarri-hiltea izaten zen eta txarri-afaria neure etorreragaz bat egiten eben.

Kontzezino egun batez, herriko mutilen edo «Luistarren» meza eta jaunartze eguna izaten zelarik, Gabonetan abendua kantetan urteteko plana sortu zen. Marijesien ohitura zaharra, han behintzat ia galdua, beharbada buruarinki, baina asmorik zindoenez, albora itxita, «bateltxo bat kulunkaz» doinua hautatu genduen ikasteko, zeinari egunerako berba berarizkoak nik jarriko neutsozen: «Gabon gaba bezperan ohitura dan legez, aterik ate gatoz Jesusen izenez... mesedez». Beste ahapaldi batek zinoan: «...etxanotar gazteok gatoz zuekana... limosnatxo bana». Ez dodaz osorik gogoratzen, beharbada, buru baztarrak arakatu ezkero, osotuko neukez baina. Beharreko entseiuak herriko abadeagaz egingo ebezen eta nik, hain zuzen oporretan gentozen egun berean, koruaren buru jarri eta kantuan abiatzea besterik ez neukan. Gabonetako oporrez ganera, kantu jira hatarako nekarren ilusinoa adierazoteko, berba barriak beharko neukez, neuretzako esklusiboak, besteentzat ulergarri leitekezenek ez leukie balioko-ta. Goizean seminarioko internatu zorrotzaren linboan arima izenbako

bat izatetik iluntzean eta gau pekatariaren arrimura kafetegi eleganteetako burrundada mundukoian figura agertzera, eternitate baten aldea zegoen. Mutil batzuk Zornotzara jasterik ez eben entzun gura, barre eta burla egingo euskuela-ta. Beste batzuk barriz:

—Etxanon bakarrik ibillitte, lupetzak batu besterik etxuk eingo. Pozu neusire joan bi'ok, dirue daoen lekure.

—Baietz, ba! —animatzen nituen nik be —. Ikusiko'zue zelako esitue eukik'un. Danak agoa zabalik itxik'uz.

—Ixilik ego'ai! —ezetzaren aldekoek —. Esango jjerek: nora jjatok astoterijjeu arrantzaka?

Azkenean baietzak irabazi eban eta horixe zen nire ilusinoa, Zornotza korritu, taberna bakotxari zegokon bertsoa kantatuz. Nire buruan aldez aurretik gozatzen neban arrakasta, seguru bainengoen ezuste onartua izango zela. Inori ez neutson esan zer asmo nerabilen. Gero, kantu ikasiaz ganera, lekuan lekuko koplak kantetan hasi nintzenean, lagunak txunditu ziren gehien eta entzuleak be ez gutxi. «Kojoenean» hasita, pare bat taberna pasatu genduzenerako, lagun piloa zetorkun atzetik. Nire aurreko egunak seminarioan ez ziren nagiak izan, Zornotzan kantatu beharreko bertsoak pentsetan. Gabonetan gogoa samurberago baita, oso harrera ona egin euskuen danean eta diru piloa batu genduen. Etxanoko mutilen gogoan bizi guztirako harrotasuna geratu zen eta «Torreburuko estudianteari» azala tarratada punturaino zabaldu jakon. Zornotzan be, «munduan» be, figuratxo bat bilakatu nintzen. Hurrengo egunetan han igeltsero lan egiten eban gure aitak zekarzen kontakizunak triunfalak ziren. Gure aita ezagutu dodan izaki fantasiosik benetakoena zen. Bardin zen kontatzen ebana gertatua, gertagarria zein gertagatxa izan. Nik badaezpadan haren bertsinoei ez neutsen fede lar emoten, baina neuri be aldeko sonak sinesteak ez eustan minik egiten. Sinestu neutsona Edurmendi Kafetegi famatuko neskatariko batena izan zen.

—Luzio! Zuen semie ezta abade eingo! —esan ei eutson



eta berak:

—Etxurie jjekon, ezton?

Gure aita desiatzen egoten zen, horrelako saltsak entzuteko edo, inork ezer esaten ez baeban, berak armetako. Neska gazteei grazia egiten eta hareikana atrebitzen aparteko dohaia zeukan. Gorago aitatu Autzaganeko jai eguerdian Gorozikako neska bat izan ohi zen, ikusgarria eta ikusia zela bazekiena, bere edertasuna inogaz dantzan egiteko baino goragotik planeatzen ebana. Gure aita izango zen neska haregaz dantzan egingo eban bakarra, inguruko mutil gazteak (neu barne) inbidia mihizkatzen itxita. Aitaren atrebentziak lotsatu egiten ninduen, baina bai harrotu be haren arrakastak. Hamaika lekutan kontatuko neban:

—Geure aitte da Urubarroko neskiek jantzie onartzo'tsen bakarra.

Edurmendiko neskarena esan eustanean, pauma baten lumajea harrotu zen nire baitan. Predikzino hareri ni abade egitearen pena (ezezko desioa lartxo izango zen) suposatu neutson eta, artean abadetzarako motibo sobera finkatuak eta onetsiak nituen arren, kontrako posibilitatearen arreta femeninoak nire kastitatea kilikatzen eban, bere hurbiltasun alperrekoak tristura puntu bat gehitzen eutsola. Gure aitaren fantasiak egizkoak ziren. Nireak ez dakit neure nahimenetik harago inon gauzatzen ziren (gaur be kostatzen jat bereiztea), baina nire gogoa halantxe zebilen, norabide askotarantz tiratuaren atezuan. Beroarena kenduta, hau da, hotzean ikusita, hutsa izan ete zen ha dana? Ez! Zornotzako gabon jira, hurrengo urtean errepikatuko genduena (orraingoan Edurmendiko neskari ondo begitzea eta berak zelan begitzen eustan ondo jasotzea ez jatan pasatuko) nire bizitzako bizipenik koloretsuenen artean dago, egiazki zer tamainukoa izan zen alde batera itxita. Oraintxe be azala tiran nabari dot, berbertako sentipenez, orduan baino hamaika zimur eta hamabi zimeltasun

gehiago euki arren.

Hasiera ez zen, halan be, zetazkoa izan. «Kojoenetik» abiatzea pentsatu genduen. Mutil batzuk lotsaren txontxongilo sartu ziren, buru makurrak taldearen erdian gordeta edo inork begitzen ez dauela uste ohi den atzeko deslekuetan galduta. «Kojo» zaharrak mostradore ganetik abegikor begitzen euskun eta azkenean emozionatu egin zen. Frankismo gorrian (berba biok bat egitea zilegi al da?) gengozen eta gabon kantu galdutzako hak, non eta Zornotzaren erdi erdian, euskaldunen eta isilpeko abertzaleen kolkoan sentimentu apalduak irabiatu zituen. Ez, antza, danen kolkoan. Geure txapel, brusa eta makila, kantatzen hasiz batera, txistu agresiboak entzun genduzen. Tupustari josita gelditu ginen.

—Ze ixen dok hori?

—Esaten naijjoan nik hona ezkendule sekule etorri biher!

—Ez ein jamonik! Ezer entzun ezpagendu lez.

Neu be noraezik nengoen, baina ahalegindu nintzen korua animatzen, txistuak irunsteko baizen sendo kantatuazoz. Bere zorrotxoagaz jente artean zebilen diru batzaileak eta taldeko batzuk laster begiztatu eben liskartia. Etxanoko mutil bat zen, geure artean egon beharrekoa. Haren auzoko, haren etxearen ondo-ondoko sei-zortzi mutil kantatzen ari ziren. Koadrilatik aparte samar ibilten zen arren, geure eskolalagun, herkide, auzokide genduen.

—Trankil, mutillek! Bera dok! Jamonik bez!

Amaitu genduenean, tabernako entzule guztiek txalotzen eta zoriontzen ginduezen, txistu jolearen ernegurako. «Kojo» zaharrari malkoak agertu jakozen eta ez eutson eskupeko makalari jarein. Txistu jolea hurrengo tabernan be saiatu zen, baina laster itxi eutsoen ahoa. Halan be, bere oeste-planta probokatzailez, azkeneraino jarraitu euskun, distantzia kalkulatutik. Ni baino pare bat urte zaharrago zen auzokide haregaz, hamalau urte nebazela, kontu txar bat gertatu jatan eta hatatik izan zeitekeen txuleria mendekati ha. «Politena» Kafetegian, gure kantak amaitutakoan, hor hurreratzen jat danen aurrean, esanez:

—Higaz berba ein bi'jjoat! Etorri hai egun baten gurera.

—Nik etxekoat higaz berba ein biherrik eta, ezer esan biher b'ostek, hator heu gurera, nobere euzokoai txistue joteko barrue dekona gurao neukek etxe ondoan ez ikusi baia.

Alkarrizketak labur eta tiran jarraitu eban, baina jada ez nintzen hamalau urteko mutiko ha eta ganera egun haretan, lagunez inguraturik eta Zornotzako ibilera garailea amaitzear, neu be altutik berba egiteko moduan sentitzen nintzen. Ez zen etorri eta harrezkero, alkarregaz topo egin dogun banaketan, ezer ez balitz lez berba egin dogu, ez ahaztuta nagoelako, —bera be ez segurrenik —, baina bizia datorrena da, oraingoan joanari bueltaka nabil baina. Oroitzen nazena naz. Gomuta honeik ezaba dakidazen egunean, dudan naz bizitzen jarraitzerik interesatuko ete jatan.

## Hamazortzi urteko deskoidua

Hogeta pare bat urteren bueltan, Seminarioan eta kanpoko neure inguru mugatuan bertsolaritzat kontsideratua izatearen errua hamazortzi urte nitueneko klase batek dauka. Filosofiako bigarrenean, beharbada lehenengoan, ez nago ziur, (hiru urte ziren guztira), orain gotzain den Don Karmelo Etxenagusiak euskerazko klaseak emoten ebazen, astean pare bat, eta nik ez neban hara hutsik egingo. Derioko seminarioko erdaltzulo konbiktuan zenbait abadegairen artean euskaltzaletasun zorrotza bizten ari zen urte hareitan eta euskerazko klase ofizialak lortzea, oso marjinalak ziren arren, urrats handia zen eta niretzat oasis txiki bat. Karmelo Etxenagusia irakasle ez ezik euskaltzale zen (izan al zeitekeen garai hareitan euskeraren irakasle, euskaltzale izan ezik?) eta klasetik kanpora be

hainbat lan gehigarri egiten genduen, euskal kantak batu, kantatu, grabatu eta abar. Behin, kolko barrenean guztiz hil barik zegoen harrak, lehen be ondo eskarmentaturik egon behar ebanak, barriro galduko ninduen pentsamentu bat bialdu eutson gogoari:

—Zegaittik eztozak bertso batzuk eitten hurrengo klaserako? Danak agoa zabalik itxik'ozak!

Hamabi urtegaz, herriko fraile komentuan urtebete eginda, seminariora aldatu ninduenean, nire alde guztietatiko iluntasun nahibagetuan, poztasun bakarra neukan argi.

—Hemen behintzet iñok etxostek bertsorik eskatuko!

Ez zegoen, ez, arriskurik, seminarioan inork bertsorik eskazegistan, euskera bera be isilpeko eskapua baitzen. Fraileetan baziren euskerazko klase batzuk, kanta batzuk be bai eleizan, fraile euskaldunek inoz euskeraz egiten euskuen, bazen etxekotasun zerbait, herritasun poxi bat. Seminariora jausi nintzenean, (komentura «eroan» baninduen, seminariora «jausi» egin nintzen), desherri totala jo neban. Euskalduna nintzenik be ez zen jakingo, erderaz oker egiteagaitik barre egin ez baleuste. Bertsoetatik erabat salbo nengoen han. Fraileetan lehenengo bi kurtsoak bakarrik ginen, ehunda batzuk mutiko guztira. Derioko Seminario edegi barria ez dakit zenbat kurtsok estrainatu genduen, baina hirurehun abadegaitik gora izango ginen guztira, gero sei kurtsoko Humanitateak osotu arte gehituz joango zena. Bostehun bat mutiko eta ez hain mutiko batera, moltzoan ez esatearren. Bakotxa zenbaki bat ginen. Nik erropetan 190a neukan, fraiIetzako 90ari aurretik 1 ipinita, erropa guztien zenbaki aldatzea izan ez zeiten onartu ebena. Gero lotegi korrituan, oinetakoen aldageletan, (ha zoan gazta hats umela!), ikasgelan, klaseetan, kaperan... zenbaki bat ez bazen, hizki alfabetiko bat ginen. Gerora hori despertsonaren ikurtzat jaso neban, baina ni zenbaki bat izateak ez ninduen apaltzen, ezkutatzen baino. Niretzat «Amuriza!» entzutea zen larria. Deia goitik eta ahots lodian bazetorren, berbertan ikaratuko nintzen eta ondoren ez zela ezer kezkagarria izan jakitearen pozak sekula ez eban hurrengo susto posiblearen bildurrik bigunduko. Eta beti abizenez, jakina. Izenak (Javier, Lucio, Manuel... horrelaxe idatzita badadaezpada) ez eban ezetako balio, Sinforiano edo halako bakantasun deigarria ez bazen, enfasi burlosoan ahozkatuko zena. Baziren izenez deituak izatea lortzen ebenak, baina ni ez nintzen «kutuntasun» haretara iritsiko. Giro haren barruan euskeraz egitea arriskuaren inkontzientziak bakarrik ekar zeikeen, beti be lagun oso konfiantzazko eta bakanakaz eta baztarretan. Halan be, iristen zen goikoen belarrietara, edo ezustean harrapatzen ginduezen, edo igarten euskuen, edo nonor txibatzen zen, ze, notak publikoki irakurtean, konduktaren beheragarri bat, hau be publikoki ohartuazoa, (norbera zutunik eta komunitate osoa entzuten), «hablar demasiado en vascuence durante los recreos» izaten zen.



## LITERATURAKO INPERNUA

Hirugarren kurtsoan, hamairutik hamalau urtera bitartean, literatura estrainatu genduen, astean hiru klasetan, abade ñarro, potolo eta aho handi bategaz. Astean idazlan bat aginduko euskun eta hurrengo klasean, lan zuzenduak eta ebaluatuak danen aurrean kantatzean, nirea beti suspentsoa izango zen. «¡Pero, Amuriza! ¡¡Pero, hombre, Amuriza!! ¿Cómo me haces esto? ¡Toma! ¡¡Cuatro!!». Nahiz eta ikasgai oraletan nota altuagoak lortu, hilaren azkenean ezin neban batezbesterik ezelan jaso aprobetako gitxiena zen bostera. Behin entzun behar izan neban: «¡Bien, Amuriza! ¿Dónde has copiado esto? ¡Toma! Cinco y medio!». Bosta aprobatu doia zela, bost eta erdi balentria baldin bazen, lekutan nenbilen hamarraren gailurretik. Literatura fatidikoa nire urte haretako larritasun gorrienetako bat izan zen, aurreko bildurrak eta

osteko apalmenak aste osora luzatzen ebana. Klasea amaitutakoan, hurrengo klasera bitarteko jolasaldia komunean sartuta egingo neban, negar isil eta abailduan, neure idazlaneko azpimarra gorriei begira, zer zegoen txarto igarri ezinik, ustez ondo eta batzutan dotore idatzi nebalakoan. Hurrengo klaserako tirrinak joten ebanean, papera moltzotu eta komunari entregatuko neutson, hirulau bider bonbari tiraturik, lehenengoan nekez ezkutatzen baitzen. Malkoak eta mukiak xukatzen paineloa eta brusa barrenak beratu ondoren, (egun guztirako bustitasuna patrika grisean), ahalik eta arpegi garbituenez eta gordeenez sartuko nintzen hurrengo klasera. Behin irakasleak testu liburuko zati bat irakurri eban, zelako intonazinoa emon behar jakon adierazoteko. Bakotxak bere liburutik jarraitzen geuntsola, halako baten hots egin eban:

—¡Aquí falta algo! ¿Qué es? Al que me acierte le pongo un diez. ¡A ver! ¡Venga! ¡Un diez! ¿Qué falta en esta frase?

Esanaz batera konturatu nintzen, baina ez nintzen hatza jasoten behingoan ausartu.

—¡A ver, Amuriza! ¡Habla! ¿Qué falta?

—Una coma.

—¡Sí, señor! ¿Por qué?.

—Porque es un relativo explicativo.

—¡Muy bien, Amuriza! ¡Sí, señor! Aquí tienes un diez como una casa.

Ez dot esango harrotu nintzenik, nire gogoa horretarako baino apalduago baitzegoen, baina egun haretan norbaitasun baten jabe sentitu nintzen, ahal dauenak ahal dauena-ko biziraupen hartan. Poza ez zen asko luzatu. Hurrengo idazlanean, patua iraulia izango ete zen itxaropen izpiak egi gordinaren zaplada hartu eban:

—¡Amuriza! (Zutuntzen naz larri. Salbatu ete naz?) ¡Pero hombre, Amuriza! ¿Cómo me escribes esto? Ya me has bajado la media a siete. ¡Toma! ¡Cuatro!



Hirulau astetan nire batesbezteak laster jo eban barriro lurra. Burua apurtzen neban, egunez komunean eta gauez ohean malko gaziak agortzen nebazen, baina ezin neban hain bakar nengoen zulotik urten, bakarra bainintzen apalmen haretan. Lagunekin konparetan nintzen eta ez neban ulertzen beste batzuk, ni baizen «boronoak» edo areago izanik, beste asignaturetan ni baino okerrago zebizenak izanik, zelan nik baino idazlan hobeak egiten ebezen. Literatura ez zen asignatura gogorretakoa eta ikasi behar ziren guztiak ondo ikasten nebazen, baina asteroko idazlanaren eskena krudel harek anikilatu behar ninduen. «¡A ver, Amuriza!» entzunda zutuntzen zenak gizon ospetsu bat izan behar ebala emoten badau be, ez zen hamairu urteko negargura ikaratu bat besterik, praka luzeak jazteko ondino denpora luzea falta jakona, klase amaierako tirrina axanpaz itxaroten ebana, komun zaratatsuetako aterik bazterrenean bere burua ezkutatzeko. Klasean bertan be begiak ur somatzen nebazen, baina ordena alfabetikoak beti lehen lerroan nindeukanez, ukondoa aulkiaren apal ganean eta burua eskura baturik, nahikoa ondo disimuletan neban neure nahibagea, atzekoen begiak nireetara ez iristeko moduan.

Artean erderaz ondo ikasia nintzen, edo besteen antzean behintzat, nozean akats bat egin arren. Aurreko urtean, hamabi urte nituela, erlejinoko irakasleak taulatura atara ninduen (danen aurrera atarate horrek zelan kikiltzen ninduen ez dago esaterik) eta oso ondo, ia buruz emoten ari nintzen ikaskai batean «...y la suegra de San Pedro estaba fiebre» esan nebanean, irakasleak barreari emon eutson eta ikasle guztiek algarari. Batzuk ez eben zegaitik jakingo, baina barrua askatzeko okasinoari eskapatzen izterik ez zegoen, irakaslea, ohiko portaera guztien aurka, halan barreka ikusi ezkero.

—¿Cómo, cómo? ¡A ver! Repite otra vez.

Nik ez nenkien zer zegoen oker eta barriro be «la suegra de San Pedro estaba fiebre» esan neban. Irakaslearen biga-

rren barreak eta ikaskideen algarak ez ziren txikiagoak izan. Jarraitzeko esan eustan, halako batean «¡Basta! Muy bien, siéntate en tu sitio» agindu eban, baina ohartzen nintzen irakasleari ez jakola barregura joaten. Ordurako banenkien izenak eta adjetiboak bereizten, baina «fiebre» adjetiboa zela uste neban, «estaba caliente» lez. Egun ha eta hurrengo asko pasatuko ziren, «con fiebre» esan behar zela ohartzerako. Honelako labankadak eta gehiago egingo genduzen ikasle euskaldunok, baina, hirugarren kurtsoan gengozela, nik ez neukan erdera problemarik, literaturako irakasle zapal, gizenkote eta ahohandi hak zuloratu ez banindu, sekula azalpen argigarri bat emon barik. Kurtsoaren azkenean ez zegoen niretzat asignatura ha aprobatzeko ezelako itxaropenik, irakasleak behin baino gehiagotan abertitu eustanez, txiripazko zirritu baten ilusinorik sor ez nengian. Gaur egun, eta orduan be seminariotik kanpora, suspentsoa ohiko orbela izango zen, baina niretzat kalabaza bat ondino probatzeko nengoen zorigatx fatala zen eta hara non beste zorigatx handiago batek libratu ninduen. Okerrak solidarioak dira, baina batzutan ez dabe alkar ondo koordinatzen.

## ORDAINDU EZINAREN LARRITASUNAK

Lehen urtean, Zornotzako fraile karmeldarren komentuan, urteko ordaina ez zen gauza handia, zazpirehun pezeta uste dot, etxe batzutan horixe be faltako zen baina. Bigarren urterako Etxanoko abadea, nik ez dakit zelan eta zegaitik, ni seminariora aldatzeko bidegintzan hasi zenean, oztopo nagusia diruzkoa zen, abadetza askoz karuagoa baitzen. Urtean lau mila pezeta. Hori gure etxerako karga ezinezkoa zen. Herriko abadeak hitzemon eban berak lortuko ebala bekaren bat, azkenean etxekoek onartu eben, abade izatea fraile izatea baino kontsideratuago baitzegoen, eta halantxe aldatu nintzen seminariora bigarren kurtsorako. Etxanotar bi ginen aldatuak, bestea ni baino zaharragoa. Seminarioan Etxanoko abadeak lehenengotan bisita batzuk egin euskuzen, gero mehaztuz joan zen eta azkenean gure beka esperantzak ezerezean gelditu ziren. Ha zen estutasuna, trimestre bakotxaren azkenerantz behin eta barriz abisatzen ebenean pentsinoa ordaintzeko epea amaitzen ari zela eta bizkortzeko. Lehenengo urtean, (nire bigarren kurtsoan), gure amaren kexuei eta nire erregu larriei esker, trimestre bat ordaindu eta besteak parkatu egin euskuezen, hurrengo urterako bekaren bat agertuko zen promesan. Hurrengo urtean bekarik ez zen inondik agiri eta gure amak uste eban barriro hileta jota libratuko zela. Bisita egun batez seminarioko erretore jaunagaz berba egin behar ebala esan eustan. Nik ez neban inondik gura, baina bera tematu zen eta erretorea non zegoen galdezka hasi zen. Futbol zelaian errreparatu eutson beste abadegai ugariren artean eta harantz abiatu zen. Lotsak akabatu behar ninduen. Gure ama, bere zelanbaiteko erderan, etxeko egoera urria eta atxaki guztiak jarten ari jakon eta gogoan dot erretoreak, hoztasun mingarriz entzun ondoren, zelan erantzun eutson, neuk entzuteko moduan:

—Este año no podemos aplicarle dispensa alguna, señora. Además no parece que el chico sea un prodigio.

Kurtsoa amaitzera zihoala, pare bat trimestre ordaintzeko zegozen ondino. Maiatz aldera abisu zorrotza emon eben. «Pentsino osoa ordainduta ez daukenei ez jake itziko kurtso amaierako azterketak egiten». Ordaindu bakoen zerrendak taula batean idatzita jarri ebezen, ikasgelako sarreran, bertatik sarrien pasatu behar genduen pasiluan. Etxera eskabide larria idatzi neban, barruko larritasun dana idazkeran disimulatzen ahaleginduz, gutunak irakurri egiten ebezen-da. Etxetik beste gutun batean erantzun eusten egoteko trankil, laster txahala saldu behar ebela eta hurrengo bisita egunean ekarriko eustela dirua. Bisita eguna heldu zen eta, ama ikusi nebaneko, itaundu neutson:

—Dirue ekarri'ozu?

—Ez, baia konponduko da.
—Orduen zetan etorri zara?

Bistatik alde egin neutson, komunera segurrenik, neure negarra inpotentzian ezkutatzera. Egun ha nire bizitzako krudelenetakoa izan zen. Nire izenak han jarraitzen eban «pikotan», begirada guztien lotsagarri. Ordaindu ahala eta batzurenak ezabatu ahala, nirea nabariago zihoan, beste neu lako dohakabe batzuren ondoan. Mutikoak oso krudelak dira eta pikotatik libre zegozenak, ia danak, han geratzen ziren, zerrendak irakurten eta iruzkin burlosoak egiten. Egunean hainbeste aldiz taula haren azpitik pasatu beharrak nire burua paparreraino makurtzen eban. Barrura ez zen sartzen, biderik aurkitzen ez ebalako. Azterketak iritsi ziren, dirurik ez zen iritsi eta asignatura batzutan azterketa barik itzi ninduen, Literatura tartean zela. Ez dakit ama barriro sartu zelako edo nahikoa sufrituazo euskuela pentsatu ebelako, erretoreak bere gelara deitu eustan eta nire eta etxeko egoeraz itaunka hasi jatan. Nik ez neban negar besterik egiten. Azkenean, errukiturik edo, esan eban:
—Bueno, por esta vez voy a permitir que te examinen.

Erretorearen gelatik, pasiluetan zehar eta eskilara handietan behera, zombie bat lez jatsi nintzen, komun bat aurkitu arte, neure arpegia apur bat disimulatzeko. Literaturako azterketaren txanda pasatua zen eta orduan irakasleak bere gelan izentatu eustazen ahozko azterketaren eguna eta ordua. Tribunal baten aurrean eta klasean ohi zena irakaslearen gelan eta buruz-buru izateak denpora lasaiago hartzeko modua zekarren. Azterketa ofizialeko formalismorik barik, errepaso osoa emonazo eustan eta ohartu zen testu liburu guztia, Espainiako Literatura gehien bat, azkenengo komaraino janda neroala. Beharbada hurbiltasun haretan, «¡Pero hombre, Amuriza!» bat barik, pertsona txiki bat ikusi ebalako, azkenean esan eban:



—¡Veo que has estudiado, eh! Bueno, te voy a dar un aprobado, cosa que no hubiera podido hacerte en un examen normal. ¡Has tenido suerte, Amuriza!

Halantxe libratu nintzen bizi guztirako gorgoilean josita geldituko jatan suspentso seguru hatatik. Hurrengo urtean Don Karmelo Etxenagusia etorri jakun Literaturako irakasle, bera be oso gaztea orduan, abade egin barri nik uste. Honek be laster agindu euskun idazlan bat eta 7 ipini eustan. Deskuidatu egin ete zen? Hurrengoetan be 7, 7,50... seitik zortzira bitartean ibilten nintzen, hantxe erdi samarrean, ez goiko puntan ez beheko zuloan. Puntari ez neutson begiratzen, zulotik libratzen banintzen, eta bazirudien betiko libratu nintzela. Dana erdera hutsean bazen be, Don Karmelo Etxenagusiak emon euskun aditzera euskalduna zela eta klasetik kanpora berba batzuk euskeraz egiten euskuzelakoa daukat. Baziren beste nagusi batzuk, (lau behintzat oso gogoan daukadaz), erdaldun petotzat geunkazenak, eta handik urteetara jakin genduen euskeraz bazekiela. Artean filosofian eta teologian gora ginoazen, hamazortzi urtetik gora, beraz, eta Seminarioko biziera eta pentsakera tridentino hari nahikoa zorrotz jarkitzen hasita gengozela, harritzen ginen:
—Baina zelan daiteke urteetan bizi izatea euskaldunak zirenik be ez genkien hezitzaileen menpe?

Urte gehiagoren distantziatik, ulertzen dot hareik be sistema baten menpeko piezak izan zeitekezela, baina horrek ez dau kentzen zapalgailuaren pisu guztia gure sorbalda indefentsoen ganera etor zeiten. Bazen nagusi bat, gure etxetik hurreko auzoan senideak zituena, eta hortik nenkien euskalduna zela. Haren etxekoak eta senideak guztiz herritar eta baserritarrak ziren eta auzo haretan inoz euskeraz be egina nintzen beragaz. Gero Seminarioan, bape malezia barik, euskeraz hasi nintzakon baten, erderaz erantzun eustan zorrotz eta hantxe moztu zen dana. Ez dakit

zeintzuk eta zenbat konkomitantzia gaiztoren eraginez, (beharbada Casimiro Morcillo eta Pablo Gurpide gotzain kimikoki frankisten despotismoagaitik), Derioko Seminarioa, lehenenengo urteetan, maila guztietako degenerategi lez gogoratzen dogu askok. Badira hain gomuta mingotsetik libratzeko zortea izan dabenak, baina nik behintzat, ondino ume nintzeneko aro ha zelakoa izan zen neurtzeko, badaukat erreferentzia esanguratsu bat. Preso nengoen urteetan, hamaika aldiz ames egiten neban ihesaz eta beti seminariotik izaten zen ihesaldia. Itzartu eta neure burua kartzelan aurkitzean, pentsatu ohi neban:

—Hau be ba'ok, ba! Nire igesak zegaittik kokatzen et'ozak beti seminarijjoan?

## BEKA MADARIKATUA

Aitatu beka kontuak nire umetako sustorik handienetakoa eragin eban. Fraileak itzita, udako oporren ondoren, seminariora iritsi barri nintzen, neure hamabi urtegaz, tristuraz eta bildurrez, etxe erraldoi haretan zelan atonduko ete nintzen. Fraileetan norbait nintzen, nota ezin hobeak atareak nituen, estimua be izan neban. Seminarioan ez nintzen inor. Amak agur esan eta arratsaldean han itzi ninduenean, beste ehundaka mutikoren etxekoak bidea betean trenerantz aldendu zirenean, neure burua galduta ikusi neban. Egun bereko afalorduan barri kezkagarri bat zabaldu zen. Trenera ihes egin eban mutiko bat harrapatu eta barriro ekarri ei eben. «Nora etorri nok ni?» —pentsetan neban. Mutiko hareri hirulau egunez eutsi eutsoen, baina ezin izan eben karrerarik egin eta joaten itzi behar izan eutsoen. Neure kautan heroitzat gorde neban bera, ez dakit txunditu ninduelako ala neure koldartasuna biziago sentiarazo eustalako. Bihamon goizean, meditazino, meza eta ganerakoak egin ondoren, gosarian abisu bildurgarri hau emon eben:

—Despues del desayuno ireis todos con sotana y beca a la parroquia de Derio.

—Ointxe galdu naz! —pentsatu neban—. Nik eztekot bekarik. Nun ete dao Etxanoko abadie? Ze esan bi'tsiet? Atoan etxera bielduko neue!

Gosal ondoren, lotegira igon eta sotana eta abar jantzita, beste danak eskilaretan behera abiatu zirenean, komunean sartu nintzen, baina ezin neban arterik hartu. Zelan egongo nintzen han eguerdirarte? Eta aurkitzen baninduen? Edo Derioko parrokian nire falta igarten baeben? Komunetik urten nebanerako, danak joanak ziren. Pasilu eta lotegi handietan ez zegoen burrundada joanaren arrastoak besterik. Lotegitik aurrekaldera begitu neban, laugarren solairuko altueratik, eta inor ez zen agiri Deriorantz.

—Ene ama! Joan die! Oin zelan abijjeu bi'ot neuk bakarrik? Hain arin zelan ezkuteu die?

Zeozer egin behar eta eskilaretan behera hasi nintzen, edozein zokondotan baten batek zaputzetik heldu eta «¿Dónde tienes la beca?» galdetuko ete eustan bildurrez. Beherengo pasiluan atzeko leiho batetik eta haragoko pabiloitzar handien artetik sotana txikien artalde bati erreparatu neutson.

—Ene! Hor jjoazek! Hortik nora baia?

Niri iruditu jatan Derioko eleizaldeak seminarioaren aurre aldean egon behar ebala, trenbiderantz nonbait, baina atzeko mendirantz egotea gertatu zen. Nik pentsatuko neban, ba, seminarioak parrokiari atzea emoten egon behar ebanik? Aldraratu nintzenean, oker batetik lasatu nintzen, baina beka kontuak garaunak jaten eustazen. Inor ez nebanez ezagutzen, taldetxoak aurrerantz pasa eta pasa ninoan, ea Etxanoko beste bietako bat aurkitzen neban. Hirurehun mutikoren artean ez zen erreza. Orduerdiko bidean eleizarantz hurreratu ginenean, estutu nintzen eta bide alboko munatxo baten ganean, haretx zahar baten azpitik,

Aresti abizeneko herkideari diharka hasi nintzen, bera be neugaz batera fraileetatik seminariora aldatua.

—Aresti!... Aresti!... Aresti!! —oihu egiten neban. Beste guztiek arpegi arraroz begiratzen eusten, eupada burlosoak entzuten nebazen, «se ha escapado» eta holakoak, baina nire larritasunak nonor behar eban. Halako batean han agertu zen Aresti mutiko artetik eta egundoko errieta egin eustan, esanez:

—Zetan habil, lotsagarrijjori? Eztok ikusten danak geuri begire daozela?

—Enekijjen zer ein ez nora joan-da!

—Bestien artien ibiltten eztakik ala?

Entzutekoak entzun arren, haren atzetik trankildu nintzen apur bat. Txilibitua jo eben, eleizara sartzeko. Beste meza bat entzun behar zen. Pilatu ginen, ari ginen sartzen eta pentsetan neban: «Ointxe eleixarako eskatuko'stiek bekie». Sartu ginen eta inork ez eban ezer eskatzeko plantarik agiri. Sermoia egin ebanak be ez eban beka konturik aitatu. «Mezerdijjen ixeng'ok» —pentsetan neban geroz larriago. Ezta! Orduan, ez zegoen beste aukerarik. «Eleixatik urtekeran ixeng'ok». Baginoazen kanporantz aldran eta sakan, ni ahalik erdiren badaezpada, eta eleizako ateko koska gainditzean, ninoan: «Hementxe helduko'stiek. ¡A ver, tú! Saca la beca. Eta nik ezebez! ¿Cómo has venido sin beca al Seminario?». Eleizpea pasatu genduen, ahalik arinen ingurutik urrundu nintzen eta pentsetan neban: «Hemen iñok etxekok ezer eskatzeko esperantzarik ala? Seminarijjora bueltan ixeng'ok orduen». Eguerdirako itzuli ginen, lotegietara igon eta sotanak itzita, bruzak jantzi genduzen, bazkaltzera sartu ginen jantoki handi batean, egun osoa pasatu zen eta gauez, argi nagusiak itzungi eta bonbila makal baten azpian, bakotxa bere ohean lerrotu ginenean, ezin neban ulertu zer gertatu zen. Egun haretan libratu nintzen, baina hurrengo egunean edozer gerta zeitekeen. Etxera gutun bat idaztea otu jatan, «esaiozue Etxanoko abadieri ekarteko arin nire bekie, ostantzien etxera bielduko neuriela-ta», baina ez nenkien gutunik idazterik bazegoen ez zelan bialdu behar zen eta itauntzen ez nintzen ausartu, zeozer igarriko eustelakoan. Egunak igaro ziren eta bazirudien abisu ha betetzea ahaztu egin jakela. Behin pasiluko leiho handi hareitako baten aurrean, mutiko bat beste bati esaten entzun neban:



—¡Ay va! ¡Mira dónde está mi beca!

Entzunaz batera, zurtz geratu nintzen. Mutiko harek, non itzita zeukan ahazturik, leihoko barlasaian aurkitutako prenda haxe zen «beka» zorionekoa, neuk be lehenengo egunetik soinean neroana. Oihalezko xingola gorri bat, sotana ganetik paparrean uve eginda, sorbaldetatik atzerantz, alde bietara jausten zena. Eleizarako eta okasino handietarako uniformearen osagai haxe besterik ez zen seminarioko lehen gosaritik bizi guztiko larrialdirik handienetarikoa pasarazo eustana. Seminario Txikiko lehen sei urteak edo Humanitateak estutik zabalerantz joan baziren be, (ez etxearen merituz, neure nortasunaren garapenez baino), nire azken umezaroa eta nerabezaro deritxon adingarai esplosiboa kanporantz txistik eta zirkin handirik egin barik igaro ziren. Neure kautan hatxulo bat eraiki neban eta han askatasun bat deklaratu neban, deklaratu zen areago, kanporantz ezelan be igarriko ez zena, baina tamainu batean geroz gehiago asetzen ninduena. Beharbada defentsibatik hasi nintzen askatzen. Askatasun intelektuala eta batez be morala.

Gurpide gotzainak, dana tridentinoki sailkatzeko zeukan seta bide, Seminario Txikiko sei urteak hiru komunitatetan banandu ebazen. Lehen-bigarren urtekoak «latinoak» ziren. Hirugarren-laugarrenekoak «humanistak» eta bosgarren-seigarrenekoak «retorikoak». Bai izen txotxoloa hauxe, besteei ezer kendu barik! Nire aro retorikoan (hamabost-hamasei urte) egundoko nortasun zabaltzea izan neban, barneki eta ondo disimulaturik beti be. Gogoan dot, astero egin beharreko konfesino zorrotz harei-

tan, bardin pekatuzkotzat joten zen pentsamen zelaian gertaturiko mogimentuak formalismo hutsean konfesetan nebazela. Kontzientzia osoa neukan nire barruko hatxuloan pentsamena nahi eban modura ibil zeitekeela. Kontzientzia edo beharbada segurantza osoa, nire pentsamenaz ez zela neutaz beste inor jabetuko. Inor hareitako bat Jainkoa zen, noski, gizakumearen kontrola irits ez zeitekeen zokondo guztietara heltzen zena, heldu ez ezik, bertan bizi zena. Baina neure hatxuloan laster ikasi neban Jainkoagaz ondo konpontzen, zeinari ez neutson hasarratzeko umorerik ikusten. Kanpo disziplina zorrotz haren azpian pentsamenari lasai korritzen izten neutson, baita pentsamen lizunari be, malezia handi barik baina.

Masturbazinoa, esaterako, hogei urtetik gora jakingo neban zer zen kontzeptualki, eta fisiologikoki abade egin eta gero, neuk bape tiratu barik, guztiz ezustean, egun bero batean ohe ganean etzunda nengoela, gorputza bere kabuz lehertu zenean. Harritu nintzen. «Ze ixen dok hau?». Eta behingoz harriduraren kidea ez zen ikara, atsegina baino. «Joño! Hau dok ha? Lenao jakin ixen baneu!». Gero urliari edo sandiari entzungo neutsen zelako barne kezkak sortzen jakezen, lotan ohea bustitzen ebenean, eta zelako lotsaria, goizean inoren etxeko izaretan halako mantxoia itzi beharra zeukenean. Niri ez jatan horrelakorik inoz gertatu. Nire gorputza pentsamenaren askatasunetik hutsitzen zen, antza. Hamabost-hamasei urteko pentsamenaren alkantzua intelektualki mugatua zen, noski, baina bere ahalean, edozer pentsetan izten neutson eta gozatu egiten neban, ez agian pentsakizunen atrebentziagaitik, deskubrigatxa izatearen segurantzagaitik baino. Gozatu egiten neban pentsetan, inork ezin eustala igarri pentsatuz. Retorikoen urte hareitan, umezaroko eta lehen nerabezaroko larritasunak gaindituriк (laugarren urtetik aurrera beka bat be lortu eusten), ikasketak aisa menperatzen nebazen, batzutan nabarmentzeraino, beste batzutan paso egiteko tarteaz jabetzeraino. Zigarrotxoak erretzeko temeritate arriskutsuan be abiatu



nintzen, kurtsoko zortzikotean tenore, solista be bai, pilotan trebea, futbolean ez hainbeste, musikan aurrenetakoa... Mediatik gorako nonor sentitzen hasi nintzen.

Bertsolari agertzea besterik ez neban behar, baina horixe bai ez zeitekeela. Lagun euskaldunakaz euskeraz egiteko bildurra guztiz galdua baneban be, han euskeraren unibertsorik ez zegoen usnatzerik be. Are gitxiago bertsolaritzarik. Horrek ez ninduen bape kezkatzen, pozten baino, umetatik pertsegitu ninduen bertsolari izen endredoso ha, ezin nebana egin behar izateko konpromiso larri ha, behin betiko ezabatutzat baineukan. Bururatzen jatan, noski, baina sentsazino pozgarrian, inork gehiago bertsorik ez eskatzeko segurantzan.

## Agur, Jesusen Ama

Ez dakit nongo tradizinoz edo noren errakuntzaz, Seminario Txikian bizi izan neban euskeraren une bakarra neure bizi guztiko pozik handienetakoagaz bategina daukat. Handiena esan baneu, ez dot uste nire beste bibentziak agrabiatuko litzatekezenik. Udako oporretan etxera ginoazen eguneko meza «Agur, Jesusen Ama» kantatuz amaituko zen. «Agur, Jesusen Ama, Birjina maitea, agur itsasoko izar dizdiratzailea. Agur, zeruko eguzki, poz hutsez betea. Agur, Ama neurea! Agur, agur, agur». Kanta hau ahazten jatan egunean, nire oroimenean ez bilatu beste ezer. Ha bai bazela benetan «poz hutsez betea». Besteen aurrean kontenitu beharra zegoen, seminarioa izteko poz handiegia erakustea susmagarri izan zeitekeen-da, baina ondoren, komunean sarturik —nire bakartoki mina, onean zein txarrean— saltorik erabakoenak egingo nebazen, pozari neurriko eskapurik ezin emonez.

Kanpoaldetik altza dagidan burua ate ganera eta dakusdan... Ez! Hemen eskolako edo espetxeko komunak nahastu jataz. Seminarioaren eraikuntza moralean ez daiteke goi libreko komu-

nik pentsa, halako erreskadan. Ezer ikusiko badot, barrura sartu beharra daukat, baina barrukoari susmo izpirik sortzen bajako, amaitu da ikuskizuna. Bonbaren tangatik burua etaraten dot eta sotana bat bere beka gorriagaz burrukan ikusten dot, komuna beteko nahasmenean, ontzi estalki bakoari zoroaldi bat antzezten, paper roiloari metroak airera tiratzen eta azkenean, pilota mendekati eta ondo estutuak ate kontratik ontziahora jaurtitzen, batzutan harrikada amorratuan, beste batzutan parabola suabean, saski baloian lez. Ez neban lehenengoan asmatuko, jokua luzatzearren. Azkenean, «Ala koño! Hi be oporretara! Zati baten nahikoa ixengo joat basoko idiaz». Bonbari tiratuko neutson, ez eban lehenengoan eroango, barriro bete arte itxaron, grrrrr psssss dzzzz, bigarrenean be oraindio pilota irunsgatxa zen, hainbakarrenean eroango eban, inoz pilota erreskatatu eta eskuagaz askatu be bai, txarrikeri konpletoa, sotana eta guztikoa, baina ezin neban bulto susmagarririk laga eta, neure barrua ustez nahikoa hustutakoan, planta indiferentez eta total arauzkoz urtengo neban pasilura, besteak ni baizen ganezka ete zebizen kalkulatuz. «Agur, Jesusen Ama». Ha zan indarra kantuan, organoa tuttian. Egun haretan, altara ganeko beirate handitik irribarrez begitzen eban Ama Birjinari maitemina deklaratzea ez zen gatxa. «Agur, Ama neurea! Agur, agur, agur!». Bi bider kantatzen zen pasarte honetan, agur erreskada hori ez zen redundantzia. Kanta osoa hirulau bider errepikatuko zen eta nik gurago hamairu, hain despedida egizkoa luzatzeak pozaren karga handitzen baiteban. Gure humanitateetako euskeraren agerpen publiko bakarrak hizkuntza bategana izan daitekeen asoziazinorik pozgarriena itzi eustan.

## NIRE LEHENENGO BERTSOAK

Hamazazpi urte maiatzean eginik, irailaren azkenetan, oporretatik bueltan, Seminario nagusian sartzen nintzen. Eraikina beste bat zen, nahizta kanpotik txikiaren egitura berekoa. Seminario nagusian hiru urteko Filosofia eta lau urteko Teologia egin beharko nebazen. Filosofiako lehen urtetik, gure buruak, batzurenak behintzat, nirea segur, disparatu egin ziren. Seminarioko disziplinaren justifikuak arras gainbeheratuko ziren. Obedituko genduen, makurtuko ginen derrigorrean, baina Filosofiako lehen urtea amaitzerako, argi ikusten neban, baita sentitzen be, biziera mortifikatzaile ha guztia absurdua zela. Don Karmelo Etxenagusiak emonda, astean euskerazko pare bat klase lortu zirenean, ni aurrenengoa izango nintzen izena emoten. Nire sentipenak ez ziren sekula etxetik, herritik, mundutik deserrotu, baina artean existentetzat be joten ez zen mundu haretara eite akademikoan itzuli ahal izatea mendeku dohatsua izan zen. Hiru ordu laureneko klaseak ez eban askorik emoten, baina hamaika ordu kenduko neutson asteari. Sobratzen jatan edo sobrarazoten neban diru apurra euskerazko liburuak erosteko izango zen. Orduan ez nebazen liburuak «irakurten» soilik, «estudiatzen» baino. Berbak, esakerak, dana ulertu eta ikasi arte ez neutson bakerik emongo. Zintzotasun honek hamaika gauza alperreko ikasiazo euskun eta ondino be ez dira motiboak amaitu, baina saiatzen naz definitibo usainik hartzen ez dautsedan kontuakaz bururik alperrik ez nekatzen.

Liburu harein artean, bertsozkoak ez ziren gitxi eta gustatzen jatazen guztiak buruz ikasten nebazen. Ehundaka bertso sartu zen nire buruan eta okerrena burua bera hasi jatala mundu haretarantz tiratzen. Eta bildurra neutson tentazinoa aurrez aurre ikusi neban, forma aluzinagarrian: «Zegaittik eztozak bertso batzuk eitten, euskerazko klasien kantetako?». Lehenengoan, pentsakizun burubako ha laster uxatu neban. Nik ez neban bertsolari izan gura. Umetako pasadizo kasual bategaitik leporatu eusten izen harek sufrimentua eta larritasuna besterik ez eban ekarri. Kostata, baina ahaztuazo neban «bertsolari» deitura. Horixe zen seminarioko erdaltasun hertsiak hain efikazki ezabatzen lagun-

du eustan eskergarri bakarra. Oporretan, auzoko edo herriko nonork tarteka gogoratuko ninduen «umetan bertsolarijje ixen zana» lez, baina inork ez eustan hain larri jarten ninduen bertso eskerik egiten. Hori guztia lortuta neukala, zelan hasiko nintzen atzera bertsolari agertzen?

Ganera musikazale itsua nintzen. Zoritxarrez nire pianogintzak ez eban buruan neukan trebetasunik atzamarretan ipini. Fraileetako lehenengo urtean izena emon neban, baina ez zen txandarik niganaino heldu. Bigarren urtean, dagoeneko seminarioan, ez nintzen izenik ezertan emoten ausartuko, ezta Ama Birjina biluzik agertu balitzat be. Hirugarren urtean izena emon neban, baina ez ninduen izentatu. Orduan neure kontura, isilka eta arriskuan, pianorik piano hasi nintzen, baten bat libre harrapatzen neban guztian, lagun pianistakandik hamaika berba txar eta arbuio harturik. Laugarren urtean, nire piano-lapur fama inkorregiblea etxe guztian aitatua zenez gero, nahitaez emon behar izan eusten toki bat pianisten zerrendan. Hamalau urte banituen. Adin aurreratu samarrean baino gehiago nire hatzetan zegoen pekatua. Ia oinez ikasi nebanetik, aurrean ikusten neban horma oro niretzat pilotaleku zen. Beste aukera handirik ez izaki, esku pilota izan zen nire umetako jolas eta zaletasun nagusia, nahikoa trebea izateraino, eskumaz zein ezkerrez. Hamalau urterako, eskuak apurtuta eta artikulazinoak zurrunduta neukazen. Nintzen pilotazale amorratua izanik, pianoari heldu neutsonetik, nire eskuetara ez zen gehiago pilotarik sartuko. Ezta ikutu be! Pianoan berehalaxe egin nebazen aurreraldi izugarriak, baina laster aurkitu nintzen muga fisiko etsigarrietan. Atzamarrek ezin eutson buruari jarraitu. Filosofian euskerazko klaseak abiatu zireneko, pianoan aurrera ninoan, baina neure muga gaindigatxen jakitun. Aldamenean ikusten nebazen lagun batzuren trebetasuna eukitzera, segurrenik ez nintzen euskeran be hasiko. Ez neban ulertzen zelan zeitekeen, abildadea eukita, futbolean, pasioan edo nozbehinka egin ohi ziren mendi urtekeretan ibiltea, piano bat libre itzita. Niretzat orduan (oraintxe be ez dakit), zoriona piano eta organo bategaz bakarturik lagatzea izango zen, pianista on baten eskuakaz, baina ezin neban eta hamazortzi bat urtegaz etsiari emoten hasita nengoen. Halan be, musika ez baitzen hori bakarrik, nire kolkoa norbaitek ziztatzen eban, ea zetako behar neban bertsoetan sasitu, musikarantz igon ahal izanda. Baneukan musikaz beste amesik be, pentsamen mailan batik bat, ez bainenbilen alperrik filosofian.



Bertsoen tentazinoa itzuli egiten zen, ostera. Ez zen bistaregi jarriko. Gehienik be belarri ostean, noznahi takada bat sentitzeko moduan. Tak joan, tak etorri, baina gero eta zarratuago eta tiragarriago. Baten batek zinoan nire kolkoan:

—Ha ixengo litzakek ezustie, hik klasien danba bertsoak kantetie! Danak ikeratute itxiko heunkezak, begijjek urten bihe-rrien. Ene! Bertsolarijje haz ala? Noztik? Zelan? Irekaslie be agoa zabalik geratuk'ok. Da klasien ez ezik, seminarijjo guztijjen zabalduk'ok. A ze bijjotzerrie eingo jjaken goikoai!

Honelako eta bestelako pentsakizun ugari zebilen nire buruan, euskerazko klasean bertsoak kantatzeko ahalbidea otu jatanetik. Ez, bai, ez, bai, egunak aurrera zihoazen gero eta ezbai obsesiboagoan eta, azkenean, iristea determinaturik zegoen zoroegun bateko iluntze batean, baietz erabagi neban. «Bijjer bertan eta kittu! Eta bijjerko biribiltzen ezpotaz, hurrengo klasien». Gaia be tentazinoagaz batera ibili zen buruan eta egunari pentsetako geratzen jakozen isilune guztietan, eleizkizun, ikastordu eta jatordu (honeik be isilean ziren), nire buruak bertsoak ontzen ziharduen, baina ez eban, gauez oheratu arte, beharreko biltasunik lortu eta gauza handirik aurreratu barik etzun nintzen. Ohean garaunak tximistatu egin ziren. Ezin neban lorik hartu, sorta osotu arte. Derrigor bihamonean kantatu behar nebazen. Hurrengo klaseari itxaroteko pazientziarik ez neukan. Nozik nozera, argia ixotu eta koartila batean idatziko neban zatiren bat,

punturen bat edo batzuk, harik eta bertsoa osotu arte. Harik eta sorta osotu arte. Harik eta eguna zabaldu arte. Gero, amaitutakoan, neure burua hareik klasean kantatzen imajinatzeak loa are urrunago bialduko eban. Nire goiz haretako meditazino, errezu eta meza lekutako desbidean igaro ziren. Hona nire bizitzako lehenengo bertso jarriak:

KALISTA ETA PATXIKO

1)

*Errosario deiari askok*
*erantzun dautse gaur ezetz*
*ohitura hain samurrak hausiaz*
*berbaz ez bada egitez.*
*Horrelako fameli gehienak*
*tribunal bihurtu direz*
*bertan senarra ta emaztea*
*dira lapur ta bai juez*
*alkarren kontu hartzea dauke*
*errosarioen ordez.*

2)

*Seinale txarrak erretolikan*
*hasten diranean biak*
*eskaratzean zer pasatzen dan*
*konturatu dira behiak.*
*Zaparradia sumau orduan*
*miauka doaz katuak*
*kontziertua zabaltzen dabe*
*kortako animaliak*
*etxe haretan zer pasatzen dan*
*badaki auzo guztiak.*



3) **Patxiko**

*Komeni diran berbatxo batzuk*
*ein behar doguz, emazte*
*lezino on bat behar dozula*
*ezin ukatu leiteke.*
*Aspalditxoan ikusten zaitut*
*neurritik gora paseute*
*azken aldian zeu egin zara*
*etxe honetan alkate*
*baina hemengo prakadun neu naz*
*behintzat bizi nazen arte.*

4) **Kalista**

*Nire aurretik zeu zagoz, senar*
*lezino baten beharrez*
*errenditzea gura badozu*
*txakurra uzabari lez.*
*Zure azpian bizitzekotan*
*ez nintzan ni ezkondu, ez*
*kriadatzat hartuta naukazu*
*baina hor oker zabiltzez*
*alkate ez bada zu beste banaz*
*behintzat neu bizi nazenez.*

5) Patxiko

*Biok horretan bardin bagara*
*hara nik dodan dudia*
*zelan arraio ete gagozan*
*ni argal ta zu lodia.*
*Ezkondu gintzazanetik hona*
*loditu zara arroia*
*zeure neurrian gizen bozu*
*kortan dagoan txarria*
*ardura barik izango dogu*
*urte guztiko urdaia.*

6) Kalista

*Loditasuna ta argaltasuna*
*ez dagoz geure aldetik*
*danok daukagu diferentzia*
*bardinak izanagaitik.*
*Lodi banago nundik ibili*
*ondo dakidalako nik*
*ze zuk oin arte emonikoaz*
*oingo hil nintzan goserik.*

7) Patxiko

*Ai sorgin lapur, harrapau zaitut*
*tranpan zeuk ez dakizula*
*zeure agotik autortu dozu*
*pekataria zarela.*
*Jan-edanean zabiz orduan*
*senarra kanpotik dala*
*besteak barriz ondino dino*
*nigaitik gosez hil zala*
*berez urtutzen ete da orduan*
*nik dakartsudan jornala.*



8) Kalista

*Ezkondu ginanean eleizan*
*egin gendun kontratia*
*bion gauzetan biok dogula*
*lege bardinez partia.*
*Hagaitik neuri tokatzen jata*
*zure jornalen erdia*
*etxera orduko gastatzen bozu*
*tabernan zeure partia*
*neurea dala dino legeak*
*osorik beste zatia.*

9) Patxiko

*Baserri baterako zara zu*
*lar listatxua, Kalista*
*senarrarena erdibitzea*
*zeurea osoan gordeta.*
*Ardaozalea neuri nazela*
*zeu barriz amorratuta*
*mozkorraldiko kolpeakin dau*
*eperdia mailatuta*
*satorren bila zeuk be ez dozu*
*surra piper gorrituta.*

**10) Kalista**

*Zeu be ezara aingerua ta*
*ez ein hainbeste zarata*
*nik surra gorri baina zuk prakak*
*atzeko aldetik bustita.*
*Bart gabean zer ebali dozun*
*enteratu da Kalista*
*kalean zehar ibil zinala*
*prakak aldrebes jantzita*
*eta jakina, larri aldian*
*behar bat aurreratuta.*

**11)**

*Hauxe matrimonio bikaina*
*Kalista eta Patxiko*
*zeuek igarri bion artean*
*zein ete dan mozkorrago.*
*Parrokoari agindu dautse*
*hau bai dala harritzeko*
*euren enterru egunerako*
*mesedez ez aztutzeko*
*uretan barik ardaotan ondo*
*isopoa bustitzeko.*

Honeixek dira nire euskerazko lehenengo bertsoen ohore xaloa daroenak. Bertso bat lau puntukoa da. Segurrenik bosgarrena laster kontatuko dodan bide bitxian galduko zen. Zortzigarren bertsoan «partia» bi bider agertzen da. Gogoan daukat, oso gogoan, zelan ibili nintzen burua apurtzen, konponbiderik aurkitu ezinik. Azkenean beharbada etsi egingo neban, horixe ez daukat gogoan, edo beharbada hori be bideko okerra izango da. Teknika aldetik, batzutan etenik ez da errespetatzen. Ez nenkien hori zer zen. Errima aldetik be ez dago zorroztasun handirik, nahizta batzuk gaur be ez litzatekezen hain txarrak. Gogoan daukat bigarren bertsoko «katuak» ez nebala egoki ikusten, baina, hamaika buelta eragin arren, ez neban konpontzeko maleziarik izan eta gorago aitatu bideak be ez eban zuzendu. Gaiari buruz, barriz, harrigarri emon daike Filosofian gora doan estudiante batek hain erretolika ruralari heltzea, baina nik euskera mundu horrexegaz bategina neukan, hangoxea nintzen, mundu haxe maite eta sentitzen neban eta ganera seminarioko egia zapalgarritik ihes egiteko era bat zen. Ez jatan burutik pasatu be egin seminarioko bizimoduari-edo bertsoak jarterik, ze, bururatuta be, non eta nori kantatu behar neutson sentitzen nebana, gatxetsia izateko arrisku barik? Urte batzuk geroago arte ez zen malezia hori garatuko.



### AITAREN AHOTSA

Bertso honeik, lehenengoak izanaz ganera, badabe niretzat bereziki hunkigarri gertatu zen kondaira bat. Oporretan seminariotik etxera eroan nebazen eta Gabonetan, txarri hilte eta antzeko jaietan, auzora kartetan edo senideen etxera gonbidatu ninoanean, nekez libratuko nintzen bertso honeik kantatzetik, aita tartean bazen. Ni ez nengoenean, berak kantatuko ebazen zebilen baztar guztietan, bere seme estudiantearenak zirela harro esanez. Urteak joan ziren, abade egin nintzen, preso nengoen eta bertsook guztiz ahaztuak nebazela ohartu nintzen penaz. Zamorako espetxean ahalegindu nintzen, baina puntu solte batzuk besterik ez neban berreskuratu. Espetxetik urtendakoan, baserriko kaxoi baztarrak arakatu nebazen honen eta beste paper batzuren bila, baina ez neban ezer topatu. Ez zeukela garrantzirik pentsatuz kontsolatu nintzen. Beste urte mordo bat igaro zen eta behin gure etxetik Zornotzara bitarteko Kanposene baserriko mutil batek, ELKAR-en lan egiten ebanak, dinost:

—Gure etxien bajjaok zintte bat, zuen aitten kantakaz eta

bertsoakaz.

—Bai? Zelan? Nundik? Kopijje bat etarak'ostek?

Gure aita aspaldi hila zen, preso nengoela. Igeltsero gisan, etxerik etxe konponketa txikiak egiten ibilten zen eta, zebilen toki guztietan kantua eta ipuina zerabilenez gero, Kanposenen be halako saioren batzuk egin izango ebazen eta buru probidentzialen bateri kasetean grabatzea otu jakon. Gure aitaren ahotsik ez genduen beste inon kontserbetan eta zinta ha entzuteak zeharo hunkitu ninduen. Eta hara, beste zenbait freskura eta kantaren artean, non entzuten dodazen nire lehenengo bertso honeik. Baita beste sortatxo bat be, neure bizitzan jarri neban bigarrena, hau be guztiz ahaztuta neukana. Aitak, lehenengo sorta ha kantatuz, egundoko arrakasta lortzen eban, bere ustez behintzat, eta seminariotik etxera ekarri nebazen uda haretako San Antolinetan Etxanoko Epaltze auzoan kantatu ebazen behin eta barriro. Auzo haretan popularra zen gure aita eta berari be han luzitzea gustatzen jakon. Hurrengo udan dinost:

—Hi, Jabi! Bertso batzuk ein bi'stezak, San Antolinetan «galizianuei» kantetako.

«Galizianoak» eta «Galizia» epaltzetarren eta Epaltzeren ezizenak ziren, eurek be harrotasunez hartzen ebezenak. Alperrik izan zen ezezka ekitea, azkenean aitaren kapritxoa bete behar izan neban-da. Halantxe sortu ziren «galizianoen bertsoak», nire bizitzako bigarrenak, aitaren ahoan ipini nebazenak.



## GALIZIANOEN BERTSOAK

1)

*Goizean goizik itxartu naz ni*
*hemengo bolanderakin*
*eta gehiago ezin izan dot*
*aurrerantza lorik egin.*
*Merezidu dau hona etortzea*
*gitxienez urtean behin*
*gure santua bisitatzera*
*behintzat sitsak jan ez dagin*
*Epaltze bizi dan arte behintzat*
*gora gure San Antolin.*

2)

*Sasi baztarrak ikusten dodaz*
*oilasko lumaz beterik*
*horreik gehiago ez dabe egingo*
*goizean kukurrukurik.*
*Epaltzen gosez geratutzeko*
*ez ei daukie konturik*
*sardin hazurraz behintzat gaur honeik*
*ez dago konformatzerik.*

3)

*Inun badira hementxe dira*
*sekulako morroskoak*
*Fidel Castrok be behar balitu*
*soldadu aproposkoak.*
*Erritu onak ditu bai hemen*
*Andres Autzaganekoak*
*Galiziara joan barik dagoz*
*berton Galizianoak.*

4)

*Egun bat gitxi izaten dabe*
*lau egun jai hartzen dabez*
*urte guztiko jornalak hemen*
*laster urtuko leukiez.*
*Lenengo bete-bete eginda*
*babajana da azkenez*
*taberneruak hor dabiz larri*
*abasto emon ezinez*
*honein ajeak hilabetean*
*kentzen ez da izango errez.*

Bertso honeitan zortziko handi bi eta hamarreko bi dagoz. Danak hamarrekoak baldin baziren, bidean puntu bi galdu dira; baina baleiteke neuk halantxe egin izana. Erabilten genduen doinuak bietarako balio eban eta, hamarrekora iristen ez banintzen, lasai itziko neban zortzikoan. Andres Autzaganekoak burdian eroaten eban jaietarako taberna Autzaganetik Epaltzera. Andres tabernari famatu honen eroan-ekarri gorabeheratsuez beste bertso bat egin nebalakoa daukat, baina bidean galdu da, antza. Hamazortzi-hemeretzi urtegaz jarritako bertsootan, ez dakit ohartuki ala oharkabean, etena errespetatzen da eta errimaz be lehenengoak baino egokiagoak dira. Aurreratzen ari nintzen.

Kalista eta Patxikoren bertsoak seminarioko klasean kantatu nebazenean, guztiz oilarturik gelditu nintzen, danak ezustean atzeman nebazela ikusita.

—Hi bertsolarijje haz ala? —zinosten harriturik.

—Enok, baia umetan-da ibiltten nintzoan —erantzuten eban nire banitate hasbarriak.

Lagun euskaltzaleen eta, oro har, euskaldunen artean bertsolari izenak ospe erantsi bat zeukan eta higan deskubritu eben misterioak bildurtu egin ninduen, baina ez nintzen guztiz ukatzeko baizen modestoa. Lagun erdaldunekiko, barriz, txokeko gailentasuntzat sentitzen neban, batez be nonork euskeraren kontrako irakasleen aurrean esaten ebanean, ez beti intentzino xaloz:

—¡Padre! ¿Sabía que Amuriza es versolari?

—¿Versolari? ¿Qué es eso?



Itaun hau egin eban irakasleak baleiteke bertsolarien barri ez jakin izana, baina bazeukan, jakinda be, ez-jakin despektiboa egiteko beste bihotzerre. «Ixurreu hai!», pentsatzen genduen geuk be bueltako arbuioz.

Seminarioan bertsolari izena hartzeak ez eustan konpromiso handirik ekarriko, hango bizitza orokorrean oso alderdi marjinala baitzen ha, baina oporretan, auzoan eta herrian, barriro bertsolari izena ganetik kendu ezinik aurkitu nintzen. Zelan esan behar neban ezetz, gure aitak edonon eta edonoz kantatzen ebazen bertso harein arrakastaren aurrean? Arrakasta laburra, noski, baina inguruan ez zegoen hobarik. Umetan banekarrela airea, aita be halakoxea nebala, estudianteak bizkorrak izaten direla... azkenean betidanik larritu ninduen zuloan nengoen barriro. Abadegai lez, nire jai esparrua oso mugatua izan arren, beti nengoen «botaik bertso bat» noz entzungo bildurrez. Alde batetik jai giroa hurreratu gura eta bestetik ezin gehiegi barruratu, zorioneko bertsoa zela bide. Neure kontura saiatzen nintzen, areago prebentzinoz, derrigor kantatu beharra gertatzen zenean, defendatzen jakiteko. Ez zen, noski, «derrigor» zorrotza, baina jentea gogaikarri jarten zenean, ez nenkien zulotik eskapatzen.

## Euskal Herriko finala irratitik

Hemeretzi urte nituen uda haretan bertan, Euskal Herriko gerrosteko lehenengo Txapelketa Nagusiaren finala zen Donostian. Artean Afrikan soldadu egondako anaia zaharragoak irrati transistore bat ekarri eban bueltan eta gure etxea ez eban gitxi alaitu

trepetxu txiki harek, batez be Arrate Irratiak zabaltzen eban soinu hotsaz. Finala irratiz emongo eben eta domekan hamarretako mezatik arin etxeratuko nintzen. Abadegaiok domekaro meza bi entzun behar izaten genduzen, goizekoa eta hamarretakoa, eta gehiago ez zegoelako, Etxanon behintzat.

Eskaratzeko mahai ganean, erdi erdian, irratia ipini eta han gengozen aita eta biok, Donostitik zetozen bertsoak entzuten. Nik ez neban bertsolaririk inoz entzun, ezta ezagutu be, urte haretan Bizkaiko finalera, Bilboko zezenplazara, joan nintzen arte. Mugartegi eta Azpillaga sailkatu ziren Bizkaitik Donostiarako. Basarri eta Uztapideren izenak entzunak nebazen, baita neure kautan mitifikatuak be, baina harein ahotsik sekula entzuteke nengoen. Donostiako finaleko ahotsak Torreburuko eskaratzeko mahai ganean entzuten hasi zirenean, hankek dardar egiten eusten, gorputz osoan zirradak zabaltzen ziren. Ama edo baten bat eskaratzean sartzen bazen, «egon ixilik!» hots egingo geuntson, edo «kanpora hemendik», txakurra bazen. Irrati primario harek zehaztasunean galtzen ebana burrundadan irabazten eban eta dana zen misterioaren handigarri. Emozinoa gorputzaren jabe zebilen, dana berea baileban. Mahaiari eta irratiari jositako entzumen miragarriro dohatsu bat nintzen. Hain hur, hain bertan, hain benetan sentitzen dot oraintxe be, ezen ez dot larregi barnatu nahi izaten, bueltan orainera saltatzeko gauza izango ez ete nazen bildurrez. Bai dela ederra oroimena, dagoeneko existitzen be ez diren munduak (etxe, pertsona, animalia) hain karga arinean eta egizkoan gordetzen dituena, gaztetasuna barru!

Egun haretako nire sentipenak aztertzen hastean, ohartzen naz emozino handiagoak biziak nebazela. Händelen Alleluyak, esaterako, nire gorputza bortizkiago inarrosiko eban, batez be geuk kantatzen genduenean. Bachen organoko «Toccata eta Fuga» batek airean eroango ninduen, kometa baten isatsa lez. Ordurako bizipen musikal indartsuen jasaile nintzen. Bardin literaturan eta pentsamen mailan. Nire burua egizko mitoz beteá zegoen, alegiazkoei ez baineutsen jaramon handirik egiten. Baita kirolean be. Noznahi ames egina neban munduko txirrindulari onena nintzela, onena ez ezik danak atzean lotsagarri izten nebazena. Futbolean golik pentsagatxenak sartzen nebazen, txiribueltan, airean horizontalki errematatuz, atetik ateraino driblinean danak jesarrita itziz, eta azkenean, atezainak, ia negarrez, parkatzeko eskatzen eustanean, publikoari begira atzez eta orpoz sartuko neban gola, atezaina belauniko lagata. Honeik danak errealki imajinatuz, egitan gozatzen neban, haragitan zirraratzen nintzen. Emozino fisikoak, bortitzak ziren, baina kanpotik zetozen, atzeman egin ninduen. Arrate Irratitik mahai ganean entzuten nebazen bertsoen zirrada, ostera, barrutik kanporakoa zen, neure izatearen taupada bat, neu nintzen. Ezingo neukeen bertsolaria Socrates, Newton edo Händelen miresmenera altxatu, baina nor neban maiteago galdetzera, burua makurtuko neban, ez bainintzen egia autortzen ausartuko, eta egia neure maitasun ruralean zegoen, etxea, animaliak, lurra, nahinorantz ikusten nebazen mendiak eta itsasaldea, gure etxetik, miragarriro oinetan, ikusten ziren eguzki sarrera harrigarri eta inprebisibleak, gauetan etxera laguntzen eustan iretargia... Eta entzuten ari nintzen bertsolaria!

Baina ez nintzen bertsolari. Ez jatan burutik pasetan Donostian kantetan ari zirenen artekoa nintzenik ez izan neintekeenik. Izango nintzela argi zegoen bakarra abadea zen, baina hori ofizioa zen, asumiturik neukana, ez bokazinoa. Pianojole izatetik etsia nengoen, kirolari ospetsua ez neintekeen izan, pentsalari, idazle, hizlari... antzik be ez. Grina indeterminatu bat nintzen, «alperreko grina» ez izateko irrika bat.

## HIRUGARREN BERTSO SORTA

Ez nintzen bertsolari eta bururatu be ez jatan egiten abadetza eta bertsolaritza batera joan zeitekezenik. Halan be, beste bertso sorta bat ontzeko kasketaldia izan neban seminarioan. Hamazortzitik

hogeta lau urtera izateko, ez da ezer, noski, baina hortxe dagoz. Bertso honeik bai kontserbatu nebazen, abade egindakoan, zenbait okasinotan kantatu be bai eta, ez dakit zelan eta nondik, hemen daukat paper bat, ez galtzeko zortea izan dauena. Bizkaierazko orijinalaren egokitzapen ba da, handik urteetara, espetxean segurrenik, euskera batura egin nebana. Orijinala bera galdua da.

## Txepetxa eta kukua

1)

*Nor ez da itzartzen pozez*
*txoritxoen kantu hotsez.*
*Euren artean gure kukua*
*nork ez du maite bihotzez?*
*Nik ere maite nuen baina gaur*
*dudan nago bai edo ez.*

2)

*Umetatik ezaguna*
*dugu gure kuku jauna.*
*Txepetx habian han utziko du*
*bere arrautza txukuna*
*ta gero berak adarrik adar*
*kantari pasa eguna.*

3)

*Txepetx gaizoa hor dabil*
*kukuari jana non bil.*
*Ekarriala irentsi eta*
*berriz bila behar ibil*
*kuku arrotza ezin aseta*
*bure umeak gosez hil.*



4)

*Inork nahi badu ikasi*
*txepetx txikia ikusi.*
*Berak hain nekez egina duen*
*habitxoan inor nausi*
*kukua hazi, habia hausi*
*umeak sasira jausi.*

5)

*Elur, izotz nahiz uholde*
*hura neguaren alde.*
*Dudan bazagoz zer den hobea*
*txepetxari egin galde*
*neguan aske ibili ala*
*udan kukuaren mende.*

6)

*Kukuarekin heldu da*
*aurrerapena mundura.*
*Udaberriaz ongi gozatu*
*txepetx lantsuen kontura*
*gero isildu eta adio*
*orain bila ezak hura.*

7)

*Umea txepetxak hazi*
*ta heu lanaren ihesi.*
*Kantatzen ere beti lelo bat*
*besterik ez duk ikasi*
*munduan fama badaukak baina*
*ez duk askorik merezi.*

Bertso honeik jartean, gogoan daukat zelako morapilo sen-

timentala egin jatan, askatzerik lortu ez nebana. Geroago konturatuko nintzen ez zegoela egon be askabiderik. Bertsoen intentzinoa bistakoa da, handiak txikia zelan esplota daikeen, mila jukutria eginez. Konparazinoaren terminoetan, egia da kukuak txepetxari (beste hainbat txori txikiagori lez) horixe egiten dautsola eta toketan jakon txepetx gizajoak uda guztia emoten dauela kuku arrotza hazi ezinik, bere umea delakoan. Halan be, kukua maite neban, oraintxe be maite dot, nork ez dau haren etorrerako kantua maite, nahizta «beti lelo bat» izan? Kukuak hain sentipen hunkigarriak eta baikorrak sortzen daustaz, ezen, bat beharrean, txepetxa baino maiteago dodala esango baineuke. Ez! Mingarri jat aukera egin beharra. Txepetxa ezin dot «gitxiago» maite, horrek nire haregazko sentiera errebajatu egiten dauelakoa baitamost. Zelan ez dot maiteko, umetan, behiak zaintzen nebazala, ia altzoraino etorten zena, ogi birrinak bota eta bertara, ia otarteraino arrimatzen zena, txiki-txikia baina handi ustekoa, Otañok zinoanez, burdinazko adar ganean tentaldiak egingo dituena, «seguru ote daguan», arratsalde guztian inguruan ibiliko zena, txakurrari bere distantzia harturik? Neguan, barriz, oraintxe be, leihoa edegiten badot, marko oinean kokatuko da, igual ordenagailuaren ganera txast hegatuko da, umezaroko iturri ganeko harri txakurkara ha eta tresna elektroniko hau aro berekoak direla sentiarazoz. Halan be, txori hau txikiegi, ezteusegi ikusten neban Euskal Herria ordezkatzeko.

Kukua, barriz, beste era batera hain maite nebana, hurretik ikusteko aukerarik emoten ez ebana, hain misterio hurbilez inguratzen ninduena, urtean bizpairu hilabetez kantatzeko bakarrik agertzen zena, hain exotismo urrunak opatzen ebazana, udabarria ekarri eta hain adeitsu isildurik, udari bide emoten eutsona, negua non igaroten eban arduraz izten ninduena, Lazkao Txikik «kalendario gabe badaki / noiz etorri ta noiz juan» kantatu eutsona... zelan senti neikeen estatu zapaltzaile baten sinbolotzat? Gure artean egiten eban denpora laburrean, ume hazten egin beharrean, ondo egiten eban kantuari ekinez, silaba errepikatu



bakarrez bazen be. Nik uste neban txepetxak pozik eta jakinki egiten eutsola inudetza, gizakiok kukuaren xarma goza gengian. Txepetxaren handi ustea ez ete dator kukukumea hastetik? Bera lako zazpi bider handiagoa den umearen buruan kokatuko da eta, burdinazko hagean lez, handik elikatuko dau ia bera bestekoa dan moko edegia. Ez! Kukuak sentipen samurregiak eta baikorregiak eragiten ditu, zapalgailu handi baten gorrotoa beregantzeko. Gehienik be, haren maltzurkeriak mutiko tranposoen ibilerak irudika daikez, beti be klabe maitagarrian.

Berez animalia guztiak dira bardin xaloak eta liluragarriak, baina otsoa, esaterako, bildurgarri izan daiteke. Picassoren zezenak hondamen bat irudika daike. Kukuari ezin dautsogu, gurata be, karga hori erantsi, ezin dogu harenganako amorrurik edo gisako nahikunde gaiztorik sentiarazo. Beraz, bertsoak ez daitekez onak izan eta berrikutu injenioso batek be nekez konponduko leukez, kontakizunaren oinarri metaforikoa desegokia delako, gure kulturan behintzat. Jarri nebazanean eta batez be kantatzen nebazanean, ondoez bat sentitzen neban, baina ez nintzen izan zergaitik zehazki konturatzeko gauza. Orain irakurten dodaz eta alde batetik identifikatu egiten naz, metafora politikoa ez baita ezetako esplizitatzen. Kukuaren eta txepetxaren arteko gatazka deskribatzen da soilik. Baina badago azpi intentzino bat, neuk behintzat ekidin ezin dodana. Gaur be bertso honeikaz ondoez berean jarraitzen dot.

Badot beste xehetasun bitxi bat be. Nik lehenik txantxangorria barik txepetxa jarri neban kukuaren inude. Behin lagun talde handi baten aurrean kantatu nebazanean, gogoan daukat batek zelan zuzendu eustan:

—Kukuek etxok txepetx habijjen erruten, txantxangorrijjenien baino.

—Zelako ezetz? Neuk ikusitte ez baneuko!

Neu menditarra eta umezaro guztia txorien atzetik ibilia izanik, danen aurrean zuzentze harek apur bat bekoskotu egin

ninduen eta neurean tematu nintzen, baina, egia esan, inoz ez neban kukukumerik inongo habian ikusteko zorterik izan. Hain zuzen, horixe zen nire umetako irrika inoz bete bakoetako bat. Behin eskolalagun batek kukukumea eskuan erakutsi eustan, ikutu ahal izan neutson, haxe zen nire txori misteriosoa. Lagun ha trebea zen txoritan eta txori habiatan eta nik inbidia handia neutson, niri ez jatalako zorte desiratu ha sekula gertatzen. Ez dakit nondik atara neban, baina kukukumea txepetx habian hazten zelakoan nengoen eta horrek misterioa areagotu egin eban; ez baineban ulertzen txepetxaren pilota formako eta hain zulo txikiko habian kukuak zelan errun zeikeen bere arrautza handia eta gero kukukume handituak zelan urten zeikeen handik. Habiaren tamainuan bakarrik aurkitzen neban zentzua, txepetxaren txikitasunari inondik be ez zegokon etxe-bolumena kukuaren prebentzioz justifikatzen zela uste baineban. Hurrengo egunetan disimuluan egin nebazan itaunetan, danek txantxangorria esaten eusten eta halantxe aldatu neban bertsoetako pertsonaia.

Urte piloa igarota, ostera, liburu hau idazten hasi eta gero, horra non ARGIA batean, 1.668. zenbakian, irakurten dodan kukuak Europan 70 ostalari espezie baino gehiago daukazala eta «gure artean txantxangorria, txepetxa, buztanikara zuria, larre-buztanikara, negu-txirta, buztangorria eta lezkariak izan ohi dira kukuaren iruzurraren biktima arruntak». Orduan atzera pozik itzuli nebazan bertsoak euren bertsino jatorrera. Errakuntzaz bazen be, nire umezaroa bere buruaren arabera berreraiki zen. Txepetxa eta kukua bertsotan kontrajarten hasi nintzenean, ez neban pentsatu berrogei urteko prozesua abiatzen zenik.

## Enbeita Gorozikan

Gerra ostean txapelketak berrasi zirenean, Bizkaikoa izango zen lehenengoa 1958an. Ha esplosino handia izan zen. Nik orduan hamazapi urte neukazen eta ez jat egun bat sekula ahaztuko. Irailaren zortzian Gorozikako jaiak ziren. Gure aita hangoa zen eta nire urteko egunik handienetakoa haxe izango zen, goiz-eguerdiak eleizaldean pasaturik, (meza eta meza osteko ikuskizunak), amama Pagaikonera gonbidatu joango ginena. Artean Bizkaiko txapelketa jokatu barri zen eta Balendin Enbeitak urten eban txapeldun. Eguerdian, ni aitaren inguruan, tabernatik tabernara goazela, hara non entzuten dodan arrastian Enbeita datorrela Gorozikara. Barri ha entzun nebanetik zelako tentsinoan sartu nintzen esaterik ez dago. Nik ez neban Balendin ezagutzen. Estudiantea nintzen eta urtean bederatzi hilabete seminarioko itxituran egiten nebazen. Abadegaia izanik, neure sasoiko mutilakaz ezin neban ibili eta gitxiago (vade retro!) neskakaz. Baina Bizkaiko lehenengo txapelduna ezagutu egin gura neban eta hareri bertso bat kantatzeko balentriaren bihozkadak emon eustan («ha ixen zoan taupadie!») eta bai egun espektantea eta larria pasatu nebana, bertso koitadu bat atondu ezinik. «Arrastireko zeozer eingo jjoat». Eleizaldetik Pagai baserrira joanaldi luzetxoa dago. Bidean gizon eta mutil piloa abiatuko zen (andrazkoak aurretik joanak ziren) eta han-hemen, baserri hurragoetakoak banandu ahala, taldea txikituz zihoan, baina halan be mordoa, Pagaiko hiru etxeetara zihoazenakaz. Ni eztitan harein kontu «mundutarrak» entzuten, baina aldi berean arrastiko bertsoan katramilaturik. «Bezkaritten eingo jjoat». Bazkari gozo, luze eta zaratatsutik altzatu ginen eta nire bertsoa ondino poxpoloan. «Bueltan eingo jjoat, eleixaldera bidien». Hau be pasatu zen eta nire bertsoa airean. Eleizaldean aita eta beste gizonak tabernarik taberna zebizela, apartatu egiten nintzen oste batera, geroago eta larriago, bertsorik ezin nebalako burutu. Inork ez zekien nire pentsakizunen barri eta lasai itxi neikeen bertan behera, baina barruak ez eustan izten. «Hain egun gozatsue ixengo zana horretantxe lorrinddu'ok dana ta oin emon bi'ok amore?». Segurrenik ez zen honen gogoeta ohartua izan, oldartua baino. Nik orduan bertsoa azke-

netik hastea eta horrelako maleziarik ez neukan eta puntu bi neukazen, non sartuko nebazen garbi ez nenkienak. Beste biakaz betelan soil bat egiterik ez jatan bururatzen. Mutilak zelan eta zetan estutu leikeen egun eder bat! Hatan, eleiza inguruan bakar eta pentsati nenbilela, hor entzuten dot Balendin Enbeita hain tabernatan dagoela. Halakoetan gure aita ez zen bakean iztekoa eta nik zeozer kantatzeko grina baneukan, harek ez zeukan txikiagoa. Berak be moldatzen ebazen zelako-halakoak, baina harek txarrak kantatzen gehiago gozatzen eban beste guztiek onak kantatzen baino eta hortxe apurtzen ninduen. Dalako tabernara inguratu ginenean, han zegoen Balendin bere argalean, txapela zorrotz jantzia, jentez eta ikusminez inguratua. Gorozikan bazen entzutea gure etxean bertsoak kantatzen zirela eta laster entzungo neban bildurrez baizen irrikaz itxaroten nebana: «Botaijjok bertso bat Enbeitari!». Batek esatea nahikoa, beste guztiek koru egiteko. Halako unean ez neban pentsatuko zeru-lurren begi-ardatz ez nintzenik. Bat kantatu neban, Balendinek erantzun eustan eta gero, ahal zen moduan, jarraitu egin behar. Nire gaztetasun hasbarri eta galkatuarentzat egun esplosiboa izan zen ha, laster seminariora itzuli beharrak dana berriro lurperatuko baeban be.

## HARROBIKO BERTSOA

Seminarioko urteetan, hamabitik hamazortzi batera, bertsolari izenetik libratzeko ez neban ahalegin handirik egin behar izan. Udan zailtasun gehiago izaten neban, baina errez ezabatzen nintzen. Azken erremediotzat, nahikoa neban esatea abadegaiok bertsotan egitea galazota geunkala eta jenteak samur emoten eban amore. Ibilten ginen moduan baltzez jantzita, mutiko batek burumakur «seminarioan ez dauste izten» esaten badau, zaila da tematzea. Jenteak bazekusan debekuak ez zeukala zentzun handirik etxean, auzoan edo lagunarte txikietan (ez noski erromerietan!), baina ulertzen eben abadegaiak bere arauak zeukazela eta ez zela haren kontzientzia bortxatu behar. Ni ederto eta jakinki baliatzen nintzen errespeto haretaz. Uda batez, hamalau-hamabost urte nebazela, dana pikutara joango zen. Etxanora abade barria etorri zen, gaztea. Abadegai bi ginen herrian, ikasurte berekoak, eta abade barriagaz pozik ibilten ginen, ondo hartzen baikinduzen. Behin meza ostean gosaltzera konbidetan ginduzen, behin berari hara-hona laguntzera, inoz egunpasa osoak, gastu txikietarako dirua be emoten euskun, berba batez, itzel. Behin, ez dakit norako asmoz, Etxanotik gure etxera bidean zegoen harrobitik pasatu behar genduen. Laubost behargin ibiliko ziren han, danak Etxanokoak, eta geratu bat egin barik ezin aurrera joan. Abadegaiok pozik, abadearen eta harrobikoen autua entzuten. Halako batean behargin batek, abade barriari niri buruzko ezuste bat emoteko airean, hots egiten dau:

—Hori bertsolarijje da gero!

—Bersolarie? —errepikatu eban abadeak, harriturik edo harritu plantan.

—Bai! Umetan be fameue zan hori. Gogoratze'haz San Antolin bigarrenien zelan kanteu'an Epaltzen Kartzelasen kontra?

Gogoratzen nintzen, bai, baina madarikatzen neban besteek gogoratzea. Autuak guztiz larritu ninduen eta, zelan saihestu edo amaitu pentsatzen niharduela, hara non entzuten dodan:

—Botaik bertso bat hementxe!

—Bai zera! Urtietan be eztot bertsorik bota. Aiztute nao total.

—Aiztute zelan egongo haz, ba? Hori berezkoa'ok.

—Aitte be fameue deko horrek —beste behargin batek.

—Luzio Torreburuko bersolarie da? —itauntzen dau abadeak.

—Ha da, ba, inguruko kanpeoie! Gixon bromosoaorik ezan mundu honetara jaijjoko. Botaik bertso bat, mutil!

—Ezetz, ba! Ni enaz aitte, naiñun kantuen hasteko.

—Bat bakarrik, abadiek entzun deijjen.

—Abadekijjok galazota dekuz holako geuzek.

—Lekuten jjaok seminarijjoa troka honetatik! Nok jakingo jjok, ba, ezer?

—Jakin eitten die! —nik geroz estuago.

—Guk esanda ez, eztok? —dinotso abadeak beste abadekiari.

—Hori ziur, berton hiltteko! —agintzen dau honek, ganeratuz: —Botaik bat eta eztok ezer paseuko.

—Zelan botako jjoat, ba, ezin bajjoat?

—Erregutue ixitea danari gustetan yake, antza —burlatzen da abadea.

—Arpelik habil! Harrobi honetatik ezaz bertsorik kanteu barik joango.

Hau baino askoz luzeagoa izan zen tema guztiaren azpian, nire gogoa ahalegin larrian zebilen zeozer pentsetan, halabeharretik ezin aparta baneinteen. Azkenean, abadea be kontra nebala, neure burua hain inguraturik ikusi neban, ezen erremediorik ezaren aurrez aurkitu nintzen. Bota neban, bota behar bazen, zelako-halako zeozer, edo, zuzenago esanda, ez nintzen hasi, zeozer botagarria tolestu arte, eta horrexek luzatu eban hainbeste tirabira. Duda barik, nire bizitzako bertsorik dramatikoena (ez dot kalifikua esajeratzen) haxe izango zen. Alde batetik ezinaren eta ez-nahiaren oharmen osoa neukan eta bestetik larritasunaren kontra maleziarik bako indefentsinoan nengoen. Ez daukat antzik bezer kanta neikeen. Azken puntuan segurrenik «ni bezelako bertsolaririk ez da munduan aurkitzen» kantatuko neban, gure aitak hainbeste bider egin ohi ebanez. Nik ez nenkien «bezelako» hori zer zen, baina kultura latinkume eta sinespera haretan formula ez-ulertuek ez ginduezen ikaratzen. Eta danek «hori, hori» oihukatzen eben.



—Ezin ddokela ta aiztu ein jjakela ta hainbeste planta! Ikusi'ok azkenien?

Argumentu honen aurka ez dago arrazoirik. Harrobiko beharginak harro zegozen abade barriaren aurrean, abadeak gorespenak egin eustazen eta neu be unean bertan, batez be larrialdia igaro ondoren, lasaitasun harroxko batek korritu ninduen. Gero, ostera, harrobitik harago, abadea eta abadegai laguna agurturik, neure mendirantz hartu nebanean, porrotontzi bat sentitzen nintzen. Hirulau urtean ehorztea lortuta neukan mamua barriro agertu zen. Barriro hasiko jatazen «botaik bertso bat» ekinka. Mamua desehortzi eta neure geriza ehortzi behar. Bertso bat eska zeitekeen okasinoetatik alde egiten hasi behar barriro, lehen be abadegai batentzat oso okasino urriak izanik. Etxera heldu nintzen eta neure burua arbuiatzen neban, hain tentel jokatu izanagaitik. Niretzat egun tristea izan zen ha, aurrerantzean pasatu beharko nebazen larritasun guztien antizipoa sentitzen baineban. Zorionez, egunak joan ahala, ez zetorren hainbesteko galbiderik. Abadeak inoz aipamen zirkunstantzialen bat egingo eban, baina ez eustan ekiten, jente aurrean behintzat. Herritarren artean be ez neban xaxapenik jasan, beharbada neuk aurrea hartzen neutselako okasino arriskugarri posibleei. Etxanon taberna txiki bakarra zegoen. Domeketako meza ostean hantxe sortzen zen gizarte txiki bat, gizonezkoena gehienbat, musean, tutean eta abar. Abadegaiok hara hurbiltzea bagenduen, batez be abadea tartean bazen, eta nik uste babesa emoten euskuela, beharbada errukiz, gure adineko gazteen ibileratik at ikusten ginduezelako. Hamalau-hamabost urteko gaztetxoa izan arren, inoz ez eusten enbarazuan nengoenik sentiarazo, aitzitik esango neuke gizonen gizarte harek karinoz tratatu ninduela. Baina une batzutan lagunarteak, karta jokotik harago, umorezko solas giroa hartzen eban, pasadizoak, pertsonaiak, ipuinak, eta kontestu haretan «botaik bertso bat» edonoz gerta zeitekeen, urrindik hartzen neutson usaina eta ordurako aldendua nintzen.

Zornotzatik Gernikara bitarteko Autzaganen taberna bi zegozen eta nire urtekera hurbilena eta ohikoena haraxe zen, etxetik ordu lauren batera basoz. Etxeko mandatu txikiak taberna-denda haretantxe egiten genduzen eta maiz gertatzen jatan zerbaiten eroan-ekarria. Zapatu iluntze edo domeka eguerdietan be maiz izango neban joan beharren bat eta niretzat Autzaganeratzea munduratzea zen. Errepidea bertatik pasatzen zen, autoak, kamioiak, autobusak hur hurretik ikus neikezen. Tabernan, barriz, ohiko giroa, niretzat beti karinosoa. Autzagane Etxano baino mundutarrago zen, pasoko geldigunea baitzen. Etxano, Zornotza, Gorozika, Ibarruri, Muxikako, baita erdaldun, bilbotar eta edonongo, gelditzen ziren han, asko ezagutzen ez nebazenak, baina ondo begituko neutsenak. Autzagane, bere txikian, mundu edegia zen niretzat eta, inguruan eleizalderik ez abaderik ez egoteak nire abadegai izatea askoz libreago sentiazoten eban. Jantzita be ezbardin joango nintzen. Etxano parrokia zen, errespeto gune bat, Autzagane bideko taberna bat, profanoa zelanbait. Hemen «botaik bertso bat» entzuteko arriskua askoz handiagoa eta aurreikusgatxagoa zen, baina nahikoa ondo lortzen neban distantzian ibiltea, bertso eskaria gerta zeitekeen orduak eta giroak saihestuz. Arriskua sometan nebanean, ezabatu egingo nintzen.

—Nun jjaok Torreburuko estudiantie?

—Etxakiat. Hementxe jjebillan lentxoao. Etxera joango zoan.

## Gorozikako Pagai

Adin horretan nekez saihesteko okasino bat Gorozikako iraileko Andra Mari eguneko bazkaria zen, amama Pagaikorenean. Aitaren jaiotetxera konbidatu ginoazena egun handia zen niretzat. Goizean eta eguerdian eleizaldeko jira eginik, bazkaltzera Pagaira erretiratuko ginen, ordu erdi bateko bidean. Han egundoko bazkaria izango zen, sasoi haretan asko estimatzen zena, giroa be bai, leku askotatiko jentea batzen baitzen, eta oso karino handiz hartuak izaten ginen. Niretzako akats bakarra bazkal ostean zetorren. Gure aita bazkari erditik hasiko zen kantuan eta inoz, une jakin haretan, kafe-kopen ondoren, mahaitik ezabatzea lortu baneban be, gehienetan harrapaturik aurkitzen nintzen. Ez neban aurkitzen alde egitea justifikatzeko motiborik edo, joaten banintzen, deituta ez etortzeko. Gure aitak ez zeukan bakerik ni kantuan ipini arte eta han joango zen zelako-halako ekitaldi bat. Gogoan daukat behin zerbitzen ziharduen lehengusina batek zelan esan eban:

—Zuek beti zabixie tzen-da-tzen!

Esan gura eban beti horrelaxe errimatzen genduela: eukitzen, aurkitzen, pentsatzen, kostatzen... TEN beharrekoak be TZEN egingo genduzen: jakitzen, urtetzen, esatzen, egotzen... Gure orduko «berezkoa» nahikoa ezebeza zen, baina gure aitari ez eutson ardura. Berak esan eta berak barre egin, halantxe ipinten ebazen danak barreka. Ezetzean banengoen, erderaz kinatuko ninduen: «Venga, Jabi! Echa una!». Azkenean, danen aurrean, hastea beste erremediorik ez neukan. Konbidatu egunez, Mañariko osaba-izekoenean be, Ikobaltzetan, kantatu behar izan neban behin, agorrileko Andra Mari egunean. Normalean amagaz joaten ginen hara, amaren aldeko senideak baitziren, baina inoz aita be etorri zen eta, haregaz joan ezkero, ez zegoen eskapurik. Geure etxeko, Torreburuko konbidatu eguna San Bartolome hurrengo domeka izaten zen, agorrilaren azkenengoa. Hemen be problema bera eukitzen neban, baina, neure terrenoa izanik, aisago aurkitzen neban ihespidea, behin iturrira, behin oilotokira, behin nork jakin nora. Umetan ez neukan hainbeste malezia, baina, mutikotu nintzenean, bistatik aldentzen nintzen eta erduze orain bila. Non dago estudiantea eta non nintzenik be ez, harik eta jentea mahaitik altzatzen somatu arte. «Dónde demonios has andado?» itaunduko eustan gero aitak, erdera puntutik

gora pasaturik, baina dagoeneko belu zen. Gero iluntzean Autzaganera joatea izango zen, hango erromeriara. Ni be pozik joango nintzen, abadegai lez nire erromeri aukera banaketarikoa izanik. Dantzarik eta antzekorik ezingo neban egin, baina inguruan ibiltea eta begira egon ahal izatea aski mundutasun zen niretzat. Aitak hango taberna bietan kantuan jarraituko eban eta ni ahaleginduko nintzen distantzia jagoten, dirua eskatzera edo hurreratu behar ez baneban. Hak ni baino nik ha hobeto zaintzen neban, alderantziz tokatzen zen arren.

# 3. Umezaro menditarra

## Frailekune isila

Hamaika urtegaz komentura joan nintzenetik hamasei bat urtera bitartean, zenbait larritasun bakan pasatu arren, nahikoa ondo ezkutatu neban bertsolaritza, edo neure burua bertsolaritzatik. Oraingo ikuspegitik begiturik, eta euskal gizarte txiki ha ezaguturik, minberatasun puntu batez (amorru hitza gogorregia litzateke) ebokatzen dot zelan behartu ninduen bertsolari izatera, neu ezer izan barik. Argi dago hein handi batean destinoaren edo, bigunago esanda, bultzada sozialaren emoitzak garela eta destinoak azkenean lortu egiten dauela nahi ez dozuna izanazotea. Hein batean ulertzen dot, baita eskertzen be, nire izenari egokitu jakon zama. Hamaika urtegaz Zornotzako karmeldarretan sartu nintzenean, koltxoi bat eta maleta handi bat eroan nebazen eta kolkoa beteko tristura. Aitak, «Kojoenean bete-bete eindde» (ez dot uste asko jan nebanik), iluntzean komentuan itzi ninduenean, neure burua galdutzat emon neban. Aurretik baietz esaten neban, animoso ikusten ninduen, baina, eguna heldu zenean, aurreak ez eban erakutsi atzea zelan dantzatu. Eta hori karmeldar hareik nahikoa jatorrak eta euskaldunak zirela. Baina diziplina gogorra zen eta batez be etxea falta neban. Mendian bakarrik ibilten ohituta nengoen eta bat-batean ehundik gora mutikoko aldra baten osagai numeral bat nintzen. «J. A. 90» zen nire identifikazinoa erropetan. Ba al dakizue zerk pozten ninduen? «Botaik bertso bat» entzutetik libratu nintzela pentsatzeak. Negarra ezkutatu ezinik pasatu nebazen lehenengo hamabost egunetan (lantzean fraile batek igarri eta «por qué lloras?» itauntzean,

«se me ha metido una saskara en el ojo» erantzungo neban), ezin gardenago gelditu jat barren-barreneko pozkari bakarti haren bizipena: «Hemen behintzet iñok etxostek bertsorik eskatuko». Geroz hondorago aurkitzen nintzen, neure lotsorrean, inoren bistan negarrik ez egiterik ezin nebala lortu ikustean. Hamabost egunen buruan menperatu neban horraitino, disimulatu alegia, baina, gauez oheratutakoan, jario guztia batera etorten zen, isil eta ondo kontrolaturik badaezpadan. Hilabete luzea pasatuko zen, gauez negar egiteari itzi neutsonerako, gero be lantzean behin deskuidatuko nintzen baina. Hori bai, inork ez eustan bertsorik eskatzen eta zerbait handitik salbatua nintzela pentsatzen neban.

Gabonak komentuan egiteko ziren eta iritsi ziren hareik be. Opor egunak izango ziren, baina etxera barik. Eleizkizunak ohi lez izango ziren, baina ganerako ordu gehienak jolasean, zinea barne. Filme inozoak izango ziren, baina nik hantxe ikusi neban lehenengo pantaila. Basapiztiak agertzea nire zoramena izango zen. Iritsi zen Gabon afaria be, ona, gozokiduna, edari eta guztikoa, nahizta ondo neurtua. Afal ostean kantak eta halako ekitalditxoak abiatu ziren eta ausartzen zenarentzat abildadea libre zen. Ni eztitan nengoen neure aulkian, ardaotxoa edanda, dana ikusten, dana txalotzen, eta neure buru handiari eusten. Fraileek egun handi haretan geugaz afaltzen eben danek. Bat-batean oholtzatik dinoe:

—¡Ahora vendrán los versolaris!

Zauskaturik geratu nintzen. Azkoitia edo Azpeitiako pare bat mutikok han urteten dabe kantatzera. Kaka praketan egitean nengoen, mahaipera makurturik, galdu ez jatan zerbaiten bila. Ezustera egokitzen hasterako, hara non entzuten dodan:

—¡Amuriza! ¡Sal tú tambien!

—Ene ama! Niriek ein jjok!

Aita Fidel izeneko fraile zuzendariak, etorri eta besotik tiraka, zinostan:



—¡Venga, Amuriza! Que tú eres el mejor.

—¡Ay va! ¿Eres versolari? —hots egiten eben alboko lagunek eta segundo gitxi barru, «aupa, Amuriza»ka hasi ziren danak.

—¡Venga, Amuriza! ¡Animo!

Nahizta askok bertsolaria zer zen jakin ez, zerbaiten alde oihu egiteko atxakia ikusi ebenean, ujuari emon eutsoen. Mutikoak bardin dira krudelak alde zein aurka. Hara non Gabon afaria barriro amildegi bihurtu zen, betiko libraturik nengoelakoan. Zutundu naz, fraileak besotik naroa eta han nago oholtza ganean, neure buruaren txorimalo. Mutiko batzuk kantak eta bertsoak buruz kantatzen dabez (Nemesio Etxanizen «kontutxo bat, kontutxo bi, ez galdetu neri...» oso gogoan daukat) eta fraileak hots egiten dau:

—Ahora Amuriza y Fulano (ez naz lagunaren izenaz gogoratzen) van a cantar versos, pero improvisando. ¡Silencio todos, que esto es importante!

Ez naz zehatz gogoratzen bi ala hiru ginen. Hiru gehienik. Eta kantatu egin genduen, ez dakit zer eta zelan. Egundoko txaloak jo euskuezen. Lehen esan dodana: Umeen eta mutikoen zarata gogoak alde harrapatzen bazaitu, salbaturik zagoz. Aulkirantzean oihu egiten eusten:

—¡Eres un fenómeno, Amuriza!

Jesarritakoan, lerroan etorten jatazen, kurtsokoak batez be, bizkarrean joka eta aupaka, danak lagun guran. Ederto baliatzen eben euren aulkietatik mogitzeko atxakia. «Sentaos todos! Cada uno a su sitio!». Umeen eta mutikoen kontuak holakoxeak dira, orduan, orain eta beti, baina ni ez nintzen burrundada haretan ume soil bat, izakitxo amildu bat baino. Ondo esate hareik guztiek sortu eusten une bateko harrotasun ukagatxa ez zen ezer irunsten ari nintzen edo bera ni irunsten ari zen abailmenaren aldean. «Akabo! Hemen be bajjakijjiek bertsolarijje nazena!».

Nire oharmen xumeak aurreikusi ez baeban be, ez zen harritzekoa. Komentua herrian bertan zegoen eta fraileek eskolatik, abadeagandik, herritarrek kontatzen eutsenetik, nire informeak ondo jasoak zeukezen eta, gero seminarioan ez lez, bertsolari izatea (ez nintzena, baina banintzena) baloratu egiten eben, nik gurago neukeen ohore haretatik libratu baina. Zorionez gero, urte guztian zehar, ez naz gogoratzen barriro bertsorik eskatu eustenik, baina eskatuko ete eusten bildurrak ez eustan alde egin. Hurrengo urtean seminariora aldatu ninduen eta, beste estutasun batzuk pilatu ziren arren, han bai libratu nintzela zeharo arriskutik. Nondik eroan neban komentura fama ha? Auzotik eta herritik duda barik eta gure aitaren ahotik, jakina.

—Luzio! Semiek laster paseu ein bi'heu!

—Ni paseu? Ezta eternidade guztijjen ekindde be! Honek eurreratzen jjoken bittartien, neu be eurrera najjoak eta holan ezin najjok sekule harrapeu.

Honelako arrazoiakaz ahoa bete haginez barre egingo eban eta azala bete hanturaz entzun (gure aitaren izaeran urgulua ez dot uste posible zenik) bere semeak pasatu egingo ebala. Umezaroan errezago harrapatzen ninduen, arriskuak kalkulatzeko ahalmen gitxiago baineukan. Txitxi burduntzi edo baso koipetsu, esaterako. Umeak bakarrik batzen baginen, ez zegoen arriskurik, baina gure etxea erdi bakarra zen eta ez genduen ume talderik osotzen. Beste auzo bateko gaztetxoak, baita gazteak be, Torreburu aldera etorriko ziren, haxe baitzen eurentzat baso edo mendi aldea. Ni, nebarreba zaharragoen arrimura, baita bakarrean be, talde hareitara hurreratuko nintzen, eztia baino pozago, eta ondo hartzen ninduen. Gozamen itzela zen niretzat koadrilan egotea, zer zinoen entzuten eta zer egiten eben ikusten, eta, ordainez edo, aitari ikasitako kantak eta bertsoak kantatzen neutsezen, hori asko kosta barik eta gustura egiten baineban, neu be inportantea nintzelakoan. Batzutan, ostera, nekizenak amaitutakoan, bat batean kantetako eskatzen eusten.



Nire estutasuna orduantxe hasten zen, baina berandu. Gero egunean bertan edo hurrengoan aitari kontatuko eutsoen:

—Luzio! Eztakik zuen mutikoak zelako bertsoak bota'oskuzen! Laster heu baiño fameuao ixen bi'jjok horrek.

## JAI BAZKARIAK

Gure aitak jasotako barria kanpaiekin zabalduko eban zebilen inguru guztietan. Etxeko jaietan, gorago aitatu konbidatu egunean, tentsino kontradiktorioan pasatzen nebazen bazkalorduak. Jente artean egon gura neban, haxe baitzen nire umetako gozamenik handiena, inork jaramon berezirik egiten ez baeustan. Egon, entzun, ikusi. Eta, zelan ez, bazkari jaukala. Gauzarik gozoenak azken aldera etorten ziren, platanoak, menbrillua, pastela... Nik hareitatik nahikoa jan arte ez neban mahaitik alde egin gura, baina une arriskutsua zen, artean aita kantuan hasia eta umore giroa igona baitzen. Batzutan bistatik aldentzea lortzen neban, baina beste batzutan ez neban ondo kalkuletan eta akuria kaiolan lez aurkitzen nintzen. Kantatu egin behar! Behin, bazkari erdian ezkutatu nintzen, aurreko jakietatik ondo aseta. Iturrira joan nintzen. Inork ez zekien non nengoen. Oso gogoan daukat, urari eraginez eta ikuztegiaren hormetan arrastadak eginez, zelako tristura sentsazinoa neukan, han bakar bakarrik, hain maite neban mahai ingurutik eta neure lehengusu-lehengusinen artetik aparte. Denpora oso luze egin jatan, etxeratu nintzen, gozoki batzuk harrapatu gura nebazen, disimuluan, eskaratzean amak edo izeko laguntzaileren batek emonda, eta azkenean:

—Baia nun habil, txotxo, hemen danak heure bille-ta?

Prebentzino guztiak alperrik izan ziren. Gozokiz ase nintzen, anis tragotxo bat egiten itzi eusten, baina kantatzetik ez nintzen libratu. Aitaren jaiotetxean, Gorozikako Pagaiko amamare-

nean gauza beratsua gertatuko jatan iraileko Andra Mari egunean. Kantak eta buruz nekizen bertsoak kantatzeak ez eustan hain besteko ardurarik emoten, baina bat-bateko horreik nire purgatorioa ziren. Nagusien mahaian egon gura eta beti bildurrez, agindu fatidikoa («botaik bertso bat») noz entzungo. Autzaganeko tabernan be gertatzen ziren halako trantzeak. Urtean ez ziren okasino asko izango, baina gura ez dauenarentzat bakarra lar. Kondairok errepasatzean, konturatzen naz kontu honeik (etxeko jaiak, Autzagane, Pagai) lehenago be aitatuak dodazela, baina, narrazino koherentearen arauez kontra, ez noa errepikarik garbitzera: gomuta berei eragiteak ez bainau gogaitzen. Irakurleak jasan beharko dau lantzean behin neuretzat bakarrik idaztea.

### Behizain kantaria

Fama ha zabaltzeko, neuk be egiten nebazen merituak, sarritan jakinean, baina ekar zeikiezen ondorioez kargutu barik. Nire umetako lan nagusia behi-zaintza zen. Eskolatik etorri, askaldu eta erbia baino behi zorrotzagoak aurrean hartuta, basorik baso joango nintzen, txakurra lagun nebala. Nire denporapasa nagusietako bat nekizen bertso eta kanta klase guztiak kantatzea izango zen, batzutan repertorio osoa errepikatuz, denpora sobratzen baitzen. Ez neban edozelan kantatuko, ahalik ozenen baino. Orduan beti gertatzen ziren nonortzuk mendian, iratan edo beste lanen batean, nik ikusi ez arren, entzuten ninduenak. Bestela be, gure mendilepoak isuri bitara emoten dauen ezkero, behin Etxano aldetik, behin Gorozika aldetik, urrindik entzungo zen nire kantua. Banenkien entzun zeitekeela eta horrek harrotu egiten ninduen. Hainbeste ordu bakarti atseginez hornitzeko modu bat zen bai entzule imajinarioei, bai ezagutzen nebazen andra eta gizon egizkoei zelako esklamazinoek urtengo eutsen pentsatzea. Inoz arbola puntatik kantatuko neban, ez hainbeste txoriak imitatze-



arren, argiago eta urrinagotik entzun zekidan baino. «Ño! Torreburuko mutikoak jjekok samie!», pentsetan neban esango ebela.

Ez nintzen konturatzen exhibizino hak hurrengo bueltan konpromiso larriak ekarriko ebazela jente aurrean, edo, susmatzen baneban be, momentuko banitate koskorrari uko egiteko baino aparteago ikusten nebazen. Sei-zazpi urtetik hamaikara bitartean, era horretantxe joan zen nire umezaroa, bertsoa eta kantua bakar orduen betegarri nebazela. Ez neban hori bakarrik egiten, nire burua beti ari baitzen zeozer asmatzen, bakarrik dabilen edozein umeren burua lez, baina ordu asko ziren eta, danak betetzeko, bariazino handia behar zen eta, egia esan, kantatzeari gozamen handia hartu neutson, nahizta segurrenik, inguruan adin beretsuko lagunak eukitzera, jolas horri nekez ekingo neutson.

### Epaltzeko San Antolinak

Bost edo sei urte izango nebazen. Gaurtik begituta, bost gitxiegi iruditzen jat, sei be ez da asko, baina ziur zazpirik ez zela, geroago emongo dodazen datuetatik. San Antolin bigarrena zen, irailaren hiruan. Torreburutik hurren dagoen auzoak Epaltze dau izena eta bertako zaindari den San Antolin bigarrenean hara hurreratu nintzen, erromeri usainera, neure anaia zaharragoaren atzetik. Amaitutakoan, (orduan erromeria ilunagaz batera amaitu behar zen) landa baztarreko taberna-txosnan zegoen jentea eta ni be hantxe inguruan, ikusmira begiluzean. Pare bat bonbila arbolatik dingiliska oroitzen ditut, artean gautua zen mostradore ingurua argituz. Bat-batean, ez dakit zelan, korru baten erdian aurkitu nintzen, «Kartzelas» ezizeneko gizon erdi bertsolari baten belaunean jesarrita, bera be halaber enbor edo marmita edo ez dakit zeren gainean jesarrita. Gure aita ez zegoen han, harentzat laneguna baitzen. Kartzelas bertsotan hasi zen, «Torreburuko mutikoa» tentatu behar ebala kantatuz.

—Bota, Jabi! Ez parkatu, hi hori baiño gehijjao haz-ta! —

entzuten neban —. Ixi! Ixxx!

Danak isildu ziren eta ez nintzen ihesbidea planteatzeko be gauza izan. Erantzun egin neutson. Zelako bertso modua izango ete zen bera? Amaitu neban behintzat eta jentea txaloka eta aupaka hasi zen. Kartzelasek jarraitu eban eta nik be ezin atzera egin. Ez dakit zenbat bertso eta zelakoak, segurrenik danak bardintsuak eta errukarriak, baina saio bat izan zen. Entzuleek, ni poztearren segurrenik, hots egiten eben:

—Kartzelas! Ona ixengo haz, baia horren kontra eztekok zereiñik!

—Jakiñe! Hau aittegandik ikesitte jjatok eta! —amore emongo eban ondino bere altzoan nindeukan Kartzelasek eta, nire kazkezurra xerakor astinduz, goralbenak jaulkiko eustazen: —Itzel, mutiko! Aitte be paseu ein bi'hok hik! Eurrerantzien neu joango nok Torreburure eta bijjok entreneuko gozak.

Globo aluzinatu baten barruan aurkitzen nintzen, ez non nengoen ez norantz ninoan jabetasun barik. Bizipen ha, unearen eta inguruaren kokapen guztiz gardenez, neure izatearen kontzientzia baizen bertan sentitzen dot. Izatea zer da, ba, bizipen iraunkorren kontzientzia besterik? Kartzelas zutundu zen eta inguruko korru jentetsuari hots egin eutson:

—Ia, mutillek! Txaloakaz da eupada merkiekaz etxaok ezer! Hemen solteu ein bi'hok, solteu! Epaltzen holakorik eztozue sekule entzun!

Buruko txapela eskuan azpil ipinita, diru batzen hasi zen. Txakur handiek, txakur txikiek, baita pezeta gorriek be tartean, txintxin egiten eben txapelean. Aurretik antzeko prezedente bat izana bainintzen, Kartzelas bera diru batzaile zela, «diru horreik niretzat ixengo et'ozak?» pentsatzen neban, begiak beteko liluraz. Ez nintzen gertatuaz lar jabetzen, baina txanponak txapelera jausten ikusten nebazen, baita entzun be Kartzelasen txapel tarteka apropos astinduan sortzen zen zarata alegrea. Diru batzea amaitutakoan, Kartzelasek dinost:

—Pañelorik badekok?

—Baietz pentset'ot.

Halako sustoa hartu neban, painelo barik aurkituko ete nintzen. Kostatu jatan neure poltsiko txikitik zapi muskil bat etaratea.

—Zabaldu! —agintzen dau Kartzelasek eta horixe egiten dot bera jesarrita dagoen enbor edo marmita ganean. Txapeletik zapira txanpon parrastada jausi da eta berak ganeratzen dau:

—Honek danok heuriek dozak, entzun? Hurrengoan be holantxe porteu haitten!

Zapiari punta binan morapilo bi emonda, poltsatxoa eskura emon eustan. Haxe zen nire bertsolaritzako bigarren jornala eta ez edozelakoa. Poltsatxoak eskua beteko bultoa egiten eban, gehien bat txakur handiz, txakur txikiz eta errealez osoturik. A zer txoria itzuli nintzen Epaltzetik Torreburura, neure diru zorrotxoari samatik ondo helduta! Etxera sartuz batera, eskaratzeko horma-mahaia jatsi eta, poltsatxoa ganean zabaldurik, neure umezaroko lanik politena burutu neban. Diruak kontatu! Holantxe pluralean. Dozenaren bat pezeta izango ziren. Orduan dirutza haregaz gozoki denda osoa eros zeitekeen. Txanpon hareik zenbat bider kontatu nebazen Jainkoak bakarrik jakingo dau, kontatzen badaki, eta non gorde nebazen ikusi baeban, haren omnipresentzia ez da dohai kuriosoa.

## BIZKARGITIK SOINU BARRUAN

Urte haretako irailaren hiruari lau hilabete kenduta, maiatzaren hiruan gagoz. Nire bertso bizitzako egunik garrantzitsuena. Behar-

bada jaio nintzena, edo sortu nintzena, behinagoa izango da, baina ez daukadaz gogoan. Bizia sortzetik dodan arren, nire bizitza oroitzen nazena da. Maiatzaren hiruan Santikurtzak, Bizkargiko erromeri eguna. Egun haretantxe egiten nebazen... bost urte? Sei? Behintzat lehenengoz ninoan Bizkargira, aitaren eskutik. Bizkargi gure etxetik pare bat orduko bidean dago, umeak eta helduak tartean daroazen erromeria baten abiaduran. Garai hareitan zenbait herritatik letainiak abiatzen ziren, Bizkargiko mendi tontorrean meza orduráko bat egingo ebenak, goizeko hamarrak inguruan. Etxanoko partea den ezkero, hango letainiaren buru zihoan abadeak zeukan eleizkizunaren ardura, baina Larrabetzu, Gorozika, Morga, Muxika eta hainbat aldetatik igoten eben letainiek. Herri bakotxetik jente mordo bategaz abiatzen zen letainiari bidean han hemengo lagunak edo taldeak batuz joango jakozen, herri ibiltari bilakatuz. Jai giroa gorago eta ozenago nabari zen, txistulari, soinulari eta txapliguak entzunez. Umeentzat pozaren gailurretako bat zen erromeria haretan joatea. Bizkargi baino kilometro bat lehenago, ordu laurenetik ordu erdira bitarteko bidean, erromeria letainia bihurtzen zen. Kurutzea aurretik zela, abadea erreguak intonatzen hasiko zen, herriak erantzungo eban eta halantxe sartuko zen erromesaldia Bizkargiko ermitan, jarraian meza entzuteko. Meza ostean plazako erromeria hasiko zen, eguerdian aurresku eta gisakoak txistulariakaz eta arratsaldean ohiko dantza-erromeria soinulariakaz. Eskubidedun hirulau tabernarik burdietan euren zahagiak eta edariak bezperatik jasoak izango ebezen eta gozoki eta erroskila saltzailerik ez zen faltako. Erromes gehienek ermita inguruko zelai eta maldetan bazkalduko eben, etxetik eroandako janagaz. Arrastian, seirak aldean, jentea beherantz hasiko zen.

Nik sei urte egiten nebazen egun hak, Bizkargira ninoan lehenengoa izanaz ganera, baeban beste pozkari orijinal bat, beharbada inork sekula eroan ez dauena. Orduan umeak Paristik etorten ziren. Halan zen esakera eta halantxe sinestu eben adin batetik beherako ume guztiek. Neu nintzen bakarra, gure etxean eta



inguruan, Paristik etorri bakoa, gure aitaren fantasietako batek nire munduratzea Bizkargin kokatu ebalako. Besteak Paristik lez, ni erromeria harexetatik etorri nintzen, osabaren soinu barruan, kitanoei ostuta. Amaren neba bat soinularia zen, urte mordoan Muniketako erromeria bere ardurapean euki ebana. Ez dot uste Bizkargin sekula joterik izan ebanik, bakotxak bere eremu zehatzak baitzeukezen konpetentzian, baina nik sinesteko, ez zen baldintza hori behar.

—Bizkergittik zelan? —ekingo neutson aitari.

—Osabien soiñu barruen. Hara! Osaba Josek erromerijje joten ziharduen da bakixu, soiñue joteko, burue zelan atzerantz okertzen deuen. Halako baten konturetu de kittanoen karropien seintxu bet daoela otzaran, bakar bakarrik, ointxuei eta eskutxuei gorantz eraiñez eta lantzien irrintze batzuk eiñez. Piezie amaittu te txixe eitteko atxakijjen, badoa osaba Jose, sartzen deu soiñu barruen umie iñok igerri barik eta, oholtzara arin-arin igonda, erromerijje joten segiduten deu.

—Da kittanoak?

—Oh! Konturetu zienien, han ibilli zien ume bille zoratute, baia nok pentseu bi'zeuen soiñu barruen egon eittikenik?

—Baia nik negar eingo neuen!

—Ez askorik. Umientzat soiñue kanpotik hain alegrie bada, pentseu barruen egotie ze ixengo dan. Dana dala, osabiek badaezpadan, erromerijje ohi baiño lenao amaittu zeuen da illuntzireko Torreburun egoan, beijje txala eitteko eukola-ta.

—Zegaittik ez zeuen umie amumenera eroan, gurien itxi barik?

—Amari entzuna eutsolako txotxo barri bet gure zeuela.

—Noz joango gara Bizkergire?

—Apur bet hazittekoan. Ondiño txikijje zara haraino igoteko.

Zenbat bider ez ete ziren barritzen honelako autuak! Kon-

daira bera bazen be, beti sortzen ziren xehetasun ezbardinak, ezuste puntuak, nire itaunen eta aitaren fantasien arabera. Kitanoei ostua izateak ez eban esan gura kitanokumea nintzenik, honei umeak ostutzea be egozten baijaken. Hori sinestea ez jatan bape kostatu. Gure etxetik Bizkargiko tontorra bistan dago. «Handixik! Handixik!», esaten eustan eta edonoz nengoen Bizkargira begira, hara noz iritsiko ete nintzen amesean. Behin, lau bat urte nebazela, joatekoa nintzen, baina edurtea egin eban, urtegarai haretan ezohikoa guztiz. Edurrak zuritasun ameslaria zabaldu eban etxe inguruan, baina Bizkargiko plana hondatu eban. Nonoz heldu zen eguna. Aitaren eskutik, letainiaren barruan, Bizkargiko ermita ondora heldu ginenean, ez neutson besterik esaten:

—Aitte! Nun ixen zan?

—Itxaon! Mezostien erakutsiko'tsut.

Lekuan bertan egonik, meza denpora aurreko urteetako itxaronaldia baino luzeago egiten jatan. Praketatik tiratzen neutson, «goazen kanpora»ka. Aita apenas zen mezak derrigor entzuteko baizen debotoa, edo beharbada bera be nire ezinegonaz kutsatuko zen, behintzat amaitu aurretik urten genduen, banaroa ermita ostera eta gerrako zulogune bat erakutsiz, hots egiten dau:

—Hortixik!

—Hortik?

—Hortixik, bai!

—Da osaba Jose nun egoan?

—Ikust'ozu oholtza hori ermitte kontran? Hortxe joten zeuen soiñue.

Meza ostean, eguerdian, arrastiko erromerian, kitanoak be bai tartean, zulo haretara zenbat ostera eta begiratze egin neban esaterik ez dago. Ikusten neban eta ez dot esango ezin nebanik sinestu, dana sinesten baineban, baina ezin neban lilura osoa era batera neugandu. Alde egiten neban aitaren ondora, hainbeste



jenteren artean galtzeko bildurra be aldean bainerabilen, baina, zuloari atzea emoten neutsoneko, barriro itzultzeko irrika zetordan eta halantxe bota neban eguna, aitaren ingurutik zulora eta zulotik aitaren ingurura. Kitanoen ume saldo gerakak hara-hona ikusten nebazen eta nire irudimen txoriz beteak jaiotza ostu ha era guztietako bitxitasunez jazten eban, egitasun definitiborik ezin osotuz.

## Lehen saio markatzailea

Iluntzean, gautu aurretik, Autzaganera jatsi ginen, non Bizkargitik bueltako erromeria ohi zen. Aitaren ondoan, Autzaganeko taberna bietan batetik bestera ibiliko nintzen, errepidea haren eskutik gurutzatuz. Gure aita kantari zebilen, beti lez. Halako batean, Andresen tabernako mostradore aurrean, bere erreperto-rio ikasiari astindu bat emon ondoren, bertsotan hasi zen, jenteak tarteka «hori, hori, Luzio!» oihu egiten ebala. Ni aitaren praka kontran nengoen, azpitik gora ezer gitxi ikusten nebala. Hatan, ez dakit zelan eta nork altzaturik, mostradore ganean aurkitu nintzen, goiko habe zaharretatik eskegitako lukainka, makailo eta ganerako jenero artean burua apartatzen nahikoa zereginez. Aitak bertso bat amaitu eta «aupa, Jabi!» hots egin eban.

Ezin dot une haretako barne egoerarik azaldu, ez baitaukat orduko sentsazinoen jabetasunik. Ikusten nebana bakarrik daukat gogoan, oso garden dana. Taberna bete-beterik zegoen eta danak isildu ziren. Azpian aitaren arpegi koloretsua eta buruzelai bat ikusten neban, euren arpegi alegreak gorantz ebezela. Ez dakit kostata ala kosta barik, erdi automata gisan segurrenik, kantetan hasi nintzen. Zelan-halan amaituko neban, aitak jarraitu eban, nik be ez neukan beste erremediorik, ez dakit zenbat bertso edo sasi-bertso izango ziren, baina haxe zen nire bizitzako lehenengo saioa. Kantatzen ari ginela, «Kartzelas» ezizeneko gizon

bat txapela pasatzen hasi zen. Txakur handiak, txakur txikiak, errealak... txapela diruz betetzen ikusten neban mostradore ganetik, «Kartzelas»en berbetatik eta zeinuetatik neuretzat izango ete ziren kalkulatuz. Eta bizikien gogoratzen dot goardia zibil bikotearena. Urte hareitan beti, herriko beste agintariakaz batera, goardia zibil bikote batek igoten eban Bizkargira. Bueltan Autzaganetik jatsiko ziren eta hantxe zegozen atzean, kanpoko atearen alboko horma kontran. Nik goardia zibilei, ez agian geroagoko bildurra, baina orduan be kitanoei besteko erreparoa baneutsen eta hantxe ikusten nebazen, ziren baino handiago, euren trikornio enblematikoak. «Kartzelas» txapela pasatzen ari zela, nire kezka nagusia zen ea goardia zibilek dirurik botako ete eben. Baita bota be, bakotxak pezeta gorri bana! Nire begi bestela be txundituak aluzinaturik zegozen. Kartzelasek, bere lana amaitutakoan, paineloa zabaltzeko agindu eta txapelkada dirua bertara bota eustan. Berak morapilo bi emonda, poltsatxoa eskuratu eustan eta haxe izan zen nire bertsolaritzako lehenengo jornala. Aitak ni eta nik diru zorroa, halantxe jatsi nintzen mostradoretik. Gure aita ez zen bere praketan kabitzen, danen ahotik bere mutikoaren gorantzak entzunez. Hantxe sortu zen «Torreburuko mutiko bertsolariaren» mito txikia, nire bizitzaren zati handi bat betiko markatuko ebana. Etxera joateko larri nengoen, poltsatxoan zenbat diru zegoen jakiteko. Aitak ez zeukeen presa handirik hartuko, Josepa tabernandreak esan ez baleutso:

—Tirok, Luzio! Hoa etxera, Mari Jesus umien arduretan egong'ok-eta.

Nonoz abiatu ginen Autzaganetik Torrebururantz. Astoaren tripan baino ilunago zegoen eta estarta zaharrean gora aitak lepoan hankarkulo ninderoan. Bidean ez ginen isilduko, ha harro eta ni zidarra baino pozago, neure zorrotxoa paparraren kontra estutuz, pinu adarren batek harrapa ez zegian. Hogei bat minutuko basobidea eginik, Torreburuko eskaratzean sartu gineneanl,



lehenengo lana kurtzulua ixotu, mahaia jatsi eta diru kontatzea izan zen. Artean oheratua zen ama goitik marmarrean entzuten genduen:

—Orduotan umiaz etxeratute, gixona zetan egon lei eskatzien horrenbeste denporan?

Ez zen denpora galdua. Hamalau pezetatik gora izan zen, hamabostera heldu barik. Txakur handi, txakur txiki, erreal eta pezeta, (nik ez neban zentimorik ezagutu), txanpon piloa zegoen, mahai ganean zabal lehenengo eta euren pilotxoetan gero. Hogei txakur txikik, hamar txakur handik edo lau errealek pezeta bana osotzen eben. Danetik baitzegoen nahastean, mahaiko txanponeria nire begietan distiratzen zen eta uste dot honeik gehiago argitzen ebela ingurua, petrolio kea zerion kurtzulu geldoak baino. Hamalau pezeta zirela ziur nago. Handik gora sei txakur handi eta zazpi txakur txiki izan zeitekezen. Hamabosta oso gitxigaitik ez zen hornitzen. Ume batentzat ez ezik, handiagoentzat be sasoi haretan dirutza bat zen ha. Oherakoan, mundu irreal batean lokartu nintzen eta irrealitate haretatik ez dot uste sekula guztiz itzartu nazenik.

Autzaganeko jazoera hau (bardin arestiko San Antolinetakoa) unean bertan asimilatzeko ez nintzen gai. Oso bizi eta zehatz gogoratu arren, esan daiteke ez nintzela neu subjektu izan, jazoerak ganetik pasatu jatazela baino. Bost edo sei urte egin nebazen eguna zela esan dot. Baserrian animalien jaiotzak noznahi ikusirik, eta batez be eskolako lagunartean horretaz hain goiz zabaltzen zen informazinoz, zazpi urterako ziur naz banenkiela umeen etorburua ez zela Paris, zelakoa hain zehatz ez banenkien be. Autzaganeko bertso saioa aitak Bizkargira eroan ninduen lehenengoa izan zen eta bete-betean sinesturik nengoen ermita ostean ikusi barri neban zulotik osabaren soinuan etorri nintzela. Ondino fantasian bizi nintzen, beraz, eta nire lehen saio hareik be espazio fantastikoan gertatu ziren. Ezin dot esan barrutik bildurrik,

ondoezik, larritasunik edo antzeko sentipenik jasan nebanik. Gertatu egin zen eta kitu. Geroago hasi nintzen sentitzen, zentzunean aurreratu ahala, zortzi bat urtegaz edo, zein larria, zein bildurgarria zen «bertsolari» izena. Neu ohartzerako (eta ezer izan barik!) leporatu eusten ospeari eskapatu ezinik pasatu neban umezaro guztia, «botaik bertso bat» entzun neikeen okasino guztietatik ezkutatzeko ahalegin inpotentean. Oso umezaro pozkorra nekarke gogoan, bertsoaren larritasunagaitik izan ez balitz.

Nire munduratze alegiazko hauxe izan daiteke nire joate egiazkoa irudikatzeko une egokia, hori be gertatuko baita egunen batean, araua baiezten dauen salbuespena tokatzen ez bajat, eta orduan zer ardura daust arauak? Baina suposa dagidan arauak naroala. Nondik edo zelan urtengo dot mundutik? Hil nadinean, nire gorabehera bizien esku geratzen da, euron gogoan geratu dena izango bainaz, baina hori ez da ni, euren gogoa baino. Halan be, nire borondateak euren gogoa erreztu badaike, hori be umezaroko ilusinotik egin daiteke ondoen. Inoz kantatu izan dot «ni hiltzen naizen gauean behintzat eizue lo lasai». Hara! Egizue gura dozuena. Ni ez naz nor, neu ez nazenean zer egin behar dozuen agintzeko. Ez dot esango jai egin dagizuen. Suposatzen dot baten batek pena hartuko dauela eta ez neuke gura inor nigaitik jai militantean ikusterik. Suposatzen dot baten batek bertsoren bat bota gura izango dauela. Egin dagiala bere kapritxoa. Ez daust ardura jatorra izan nazela kantatzen badau be. Suposatzen dot nire hiletak ohitura baten barruan edo inguruan egin beharko direla. Neurez gurago neuke inork igarri barik aldenduko banintz eta heriotza guztiak horrelaxe balira. «Joan zen!». Hilak lepoan hartuta ibili barik. Baina ez da horrela izango eta ez neuke inorentzat konpromiso gatxegirik itzi gura, batez be nire falta sentitzeko eskubidea daukenentzat.

Orduan zer? Oizko San Kristobal zelaian haizeari zabaldu nagizue eta eginda. Ez dago antenetaraino igon beharrik. Joango naz zelaitik neuk gura dodan lekura. Oiz mendiak ia nire bizitza osoa hartzen dau. Bizkargi bistan dago, bitartean eta kate berean nire jaiotetxe inguruak Etxanorantz eta Gorozikarantz emoten dau, seminariotik Bizkargira eta Oizera begira egoten nintzen, ikusten ez neban etxea imajinatzen. Iparrerantz itsasalde amaibagea eta itsaso itzela agiri dira eta bitartean Lea Ibarra, non estrainatu neban neure abadetza eta bizitzako zatirik ederrenetarikoa, hil arte jarraituko dauena. Hegoarantz Anboto, Urkiola, Mugarra, Aramotz katea, eta Oizen beraren oinetan, jagitasun bistatsuan, orain bizi nazen etxea, Berrizko Andikoa auzoan. Bai! Mendi hauxe da nire sentimenduak inguruan darabizena. Botaiozuez nire hautsak haizeari eta libra zaiteze Domu Santuetako hilerribira goibelgarritik. Hilerria politagoa zen, ezkutuan sartu eta kurutze eta panteoi artean kubika olgetako, hilen ganean bizi zatiak izteko baino. Zabal nagizue Oizko landan, hurrengoan itzuli gura badozue, aldeta egon nadin. Edo neuk jakingo dot noz nogaz zer. Hau ez dozue eleiz-hileta bategaz konparatuko, ezta? Ez dot inoren federik mindu gura. Hemen be hango guztia sinestu zeinkie. Ez eidazue esan mundutik alde egiteko plataforma ederra ez denik. Geratzeko ederragoa da, jakina! Eskertzen dot zuen ondo beharreko «laster arte» hori, baina nigaitik zoaze lasai, beherantzean Garain trago bat osasunagaitik eginez.

# 4. Abadetza errebeldea

## «GOGOR» MOGIMENTUA

Nire abade garaia abadetzagaitik ezagunago izan zen bertsolaritzagaitik baino. Halan be, biak bateratzeak hagindura handia emon eutson nire izenari. Abadetu nintzenerako, abade mogimentuak, Bizkaian batik-bat, indar handia zeukan. Korrontean sartzea besterik ez zegoen eta buru-belarri egin neban. Korrontea ez zen, noski, maioritarioa, ezta gitxiagorik be. Eleizgizon gehienak, fraile zein abade, eleiz errejimenaren menpeko ziren eta eleiz errejimena, bere barruko disziplina eta moral estutzaileaz ganera, errejimen politikoaren ezkontide zen. Baziren frankismoa gorroto eben abade eta fraile asko, baina ez zekien menpetasun politikoa eskatzen eban eleiz obedientzia nondik saihestu. Eta lotura erlijioso eta moralez ganera, batez be bildurra zen nagusi. Bildur ikaragarria. Halan be, ni abade egiterako, lotura moralei eta bildurrari aurre egiten eutson abade mogimentua egunetik egunera indartuz zetorren eta kopurua be portzentaia testimonialetik oso gora zihoan. Gero GOGOR izena hartuko eban mogimentu hak, bistara azaltzen ginen fitxatu ugariez ganera, bagenkien kopuru zabal baten baitan oneritxi handia zeukala. Herririk herri zenbait ekimen edo sinadura batze egitean, hamaika abade eta fraileri entzungo geuntson: «Zuek tira! Guk dagoeneko ezin dogu askorik egin, gerrak eta gerrosteak betiko bildurtu baikinduzen, baina asko pozten gara, zeozer ikustera heldu garelako». Zeozer hori batez be kontestazino politikoa zen, baina baita kontestazino morala be, eleizaren mendeetako zorrozkeria zentzunbakoaren aurka, nahizta alde honek abade abertzaleen artean be hainbes-

teko oneritxirik izan ez. Gogoan daukat zelako eskandalua sortu zen inpernurik ez zegoela edo, baldin bazegoen, hutsik egongo zela esan neban baten. «Eta beterik balego be, zuen modukoekin ez!». Oso jakinki predikatzen neban mezu hori, berbak neurtzen saiatuz beti be, baina inpernuaren eta ganerako terrore moralaren euskarri askoren zentzunbakokeriak konbatituz. A zer txoriak paretan ziren eleizgizonak, honelako predikuen barri entzunda!

Bertsolari irudiak jarrera kontestarario hari indar eta estridentzia gehiago ezarten eutson. 1966ko San Isidroetan Gizaburuagan debuta egin nebanetik, inguruko herri eta auzoetatik deitzen hasi jatazen eta baneban barruan har bat, ezetz esaten izten ez eustana. Ez nintzen bertsolari konsideratzen, baina, abade izanik, ezin neban plazatik ezohartuan pasatu, esperimentu bat egiten lez. Horrek nire bertsolari maila doia erantzukizun handiegiaren aurrez jarten eban arren, aurrera egiteak baeban tira bat, baeban abenturazko eta erronkazko ertz bat, erreparo guztien ganetik ausartuazoten ninduena. Guztiz figura bakarra (plazan kantari zebilen abade-bertsolaririk ez zen ezagutzen) izatearen kontzientzia argia neukan eta nire orduko oldarrak ezin eutson aukera hari muzin egin. Nire plazak ez ziren asko, saio gehienak domeka-jaietan izaten baitziren eta gure behar apurra egun horreixetan zen hain zuzen, domekaro lau meza emonez, Gizaburuagan bi eta Amoroton beste bi. Orduan ez zegoen ondino zapatuko mezarik. Hur samar baldin bazen, eguerdi beranduratako han iritsiko nintzen plazara, lau meza eta lau sermoi eginda. Mezako hiru zurrut bider lau, guztira hamabi, ganera barauan, txikienak izanda be, garaunek igarten eutsoen. Sarritan gertatzen zen mezako sermoi entzuleak plazan bertso entzule aurkitzea. Kontraste handia zen, bai neuretzat, bai batez be eurentzat, bertsotako gaiak ez baitziren beti hain ebanjelikoak.

Oromiñoko saio bat, esaterako, gogoan daukat. Aurretik auzo haretan, ez dakit egun berean izan zen, sermoia egina nintzen eta mundu honegaz batera, beste mundua be aldatuz ez etezihoan adierazoteko, Josafateko zelaia, azken epaiketako zelai ospetsua, pinu sartu ebela esan neban. Orduan pinua prezio handian zebilen. Oromiñotar batzuri ez jaken behingoan ahaztuko eta, jakina, beste abade eta fraile batzuren belarrietara be iritsi zen eta saiatu ziren niri eta bide batez abade errebelde guztiei fama kentzen, baina herriaren aurrean, garai itzarkor haretan, esames klerikalek mindu barik harrotu egiten ginduezen, despotismo eleizkoiaren aurka gartsuago jokatzeko motiboa emonez. Arrastian, Oromiñoko plazan, beste zenbait jardunen ondoren, bertso saioa zen, neu tartean nintzela. Aurretik asto lasterketa izan zen eta astar baten bosgarren zangoak egundoko ikuskizuna eta entzunkizuna emon eban, eme baten atzetik arrantzaka. Asto lasterketak horrelakoxe zeozer ikustearren antolatzen dira eta prebisinoek nekez huts egingo dabe, astarra ez baita honestasun sozialari begira ibilten. Bertsotan «bost hankako astoak» aitatu nebazenean, jenteari, batez be jente mota bateri, asko txokatu jakon halako kontuak abade baten ahotik entzutea.

Ez zen, noski, dana freskura izango. Orduan, ondino frankismoaren zuloan, euskera, Euskal Herria eta gisako ideiak, apur bat zehazten baziren, burua makurrazoten eben. Goardia zibila gehienean aurrean zen, txibatorik ez zen falta izaten, baina guri abadetzak, errespeto sozialaz ganera, inpunitate konstituzional bat emoten euskun eta horretaz baliatu nintzen, bertsotan be sokari tiratzeko. Bagenkien hesia estutuz eta inpunitatea amaituz joango zela eta arin ibili behar zen, zegoen bitartean aprobetxetako. Grabazino batzuk goardia zibilaren koartelera iritsiko ziren, baina ez eben, antza, itzultzailerik errez aurkitzen. Ganera orduko abadeon jarduna eleizako sermoietan eta kaleko ekintzetan be nahiko frontala zen eta mogida haren guztiaren barruan, nire bertsogintza anekdotikoa zen. Gehienez be «¡Y encima versolari!» nintzen. Nozean behingo plazako saioez ganera, herrian bertan, tabernan edo ostantzeko jai okasinoetan, ez neban sekula kantatuko. Eskatzen eusten banaketan ezetz esaten bane-

ban, ez ziren gehiago ekiten ausartuko. Inoz eurakaz konfiantza giro handian ibilten nintzen umeek tentatuko ninduen:

—Don Jabier! Bota bertso bat!

Barregura handia emoten eustan hain oihartzun disoziatuak («Don Jabier» gehi «bota bertso bat») harein ahoan hain naturalki entzuteak. Umeen eskaria saihestea ez zen gatxa. Ipuinen bitartez eta abar, hareik euskeraz alfabetatzen ahaleginduko nintzen, baina bertsoakaz ezer egiterik ez jatan bururatu eta gitxiago nonorgaz edo nonortzukaz bertsotan saiatzea, seminarioan lez. Nire burua oso beste ardura batzutan zebilen orduan.

## Gotzaina entzule

Behin Abadiñon saio berezia gertatu zen. Ez dakit zer egun eta zer motibo bitarte, ospakizun handia zen behintzat, Bilboko Gotzaina be, gizon txikia eta berdea, gure Gurpide inefablea, etortekoa baitzen. Eta ni bertsotara deitua! Artean Gotzainagaz nahikoa tirabira izana nintzen, bai abade mogimentuaren barruan, bai neu neutara. Meza ostean, plazako ekitaldia solemnea izango zen. Orduan Gotzain baten etorrera parafernalia totala izaten zen, agintari erlijiosoak, zibilak eta falange guztia inguruan ebazela, euren uniformerik konpletoenakaz. Ohorezko aurreskuaren ondoren, Udaletxeko balkoitik, herriko alkateak eta beste norbaitzuek ondo etorria eta ganerako protokoloak egingo ebezen eta Gotzainak berba batzuk esango ebazen. Orduantxe entzun neban, lehenengoz eta azkenengoz, Gurpide Monsinorea euskeraz berbetan. Eta bere Otsagiko «uskara» dotore egiten eban barrabanak! Oso gogoan dot zelan ahozkatzen eban zeta hizkia, («enzun», «zu», «bizi»...) andaluzen «ese» antzera. Ez zen gaztelaniaren eragina, bere etxe hizkuntzaren ezaugarria baino. Pentsetan neban:

—Zelan ixen leik Gotzain txiki hau euskerien da Euskel Herrijjen hain arerijjo handijje?



Berbaldien ondoren, bertsolariok (ez daukat gogoan laguna nor zen) saiotxo bat egingo genduen. Aldi berean irrikaz eta artega nengoen, Gurpideren arpegi txundituа imajinatuz, hak ez baiteban inondik be itxaroten bertsolarietako bat bere «abade errebeldea» izango zenik. Segizino osoa balkoi handian zegoela, (bazen han bandera espainolik eta trapu santurik ugari) guk ondoko etxeko balkoitik ekingo geuntson. Kantuan hasi nintzenean, Gotzainari begirik kendu barik, haren arpegia, kinpula gorri bat betaurreko tridentinoakaz, kirikinorantz transfiguratzen ikusi neban. Bertsoa amaitzean, «eukik hori» pentsatu neban. Okasinoak eskatzen eban arreta eta solemnitate osoz entzun behar izan eban, bai Gurpidek berak, bai inguruko gorte erromatar guztiak. Ez dakit zelako saioa izango zen, baina, lotsabakoa izaten ahalegindu barik, ziur naz ez nebala euskera, Euskal Herria eta antzeko kontzeptuak kantatzeko aukerarik galduko. Entzuleek ohiko txaloak jo ebezen, halaber agintariek, gizalegeak agindu lez, eta gure Gotzain txikia bertsoak txalotzera beharturik, agian apaldurik, ikusteko plazerra izan neban. Gero behean, gizalegeak niri be neure agintari apostolikoa agurtzea eskatzen eustan eta atseginez aurkeztu nintzakon, haren erreakzinoa bekoz beko ikusi guran. Hots egin eustan:

—¡Pero, Amuriza! ¿También te dedicas a eso?

—Bai, Gotzain jauna. Berorrek be oso euskera polita egiten dau.

## Gurpidegaz aurrez aurre

Hak erderaz eta nik euskeraz, ez zen, ez, oso alkarrizketa humanoa izan eta gitxiago luzea. Berari be saio ha gogoan geratuko jakon, geroago ondo baieztuko nebanez. Izan be, Gurpide Gotzainagaz inkontru pertsonal luzea eta zorrotza euki neban, «Zeruko Argia»n idatzitako artikulu bat edo bi zirela-ta. Urte hareitan liturgiako latinetik ama-hizkuntzetarako trantsizinoa izan zen. Gazte-

lania behingoan nagusitu zen danean, baina euskerari, herri oso txiki eta guztiz euskaldunetan izan ezik, bitarte urria edo hutsa emoten jakon. Durangon, Gernikan eta antzeko herrietan meza bat euskeraz lortzea balentria bihurtu zen eta, lortzen bazen, ordu marjinaletan beti. «Jainkoaren hitza norbere hizkuntzan entzun ahal izateko eskubidea» euskeraren kasuan separatismoaren susmagarri bilakatu zen. Parrokia handi samarretako euskaldunik gehienek ez zeuken meza euskeraz entzuteko aukerarik. Orduan artikulu bat idatzi neban aitatu aldizkarian, baiezpen nagusi bi defendatuz. Batetik «bere eleizan edo parrokian euskerazko mezarik eskeintzen ez jakon kristinauak ez dauka meza entzuteko obligazinorik». Bestetik eta areago: «Eskubidezko jakon euskerazko meza entzutera beste eleiza batera doan kristinauak kristinauago jokatuko leuke etxean geldituta, ukatzen jakon eskubidea bere parrokiak bete dagion presionatuz». Gitxi gora behera, ideia honeik bertan garatzen ziren artikulu harek tximistak etara ebazen. Gogoan daukat orduan Belgikan zegoen Txillardegiren telegrama bat zelan hartu neban, esanez: «Txundituta nago. Zorionak». Artean ez neban Txillardegi ezagutzen eta «txunditu» hitza orduantxe ikasi neban.

Ez zen dana zorion emotea izan. Eleiz estamentuentzat eta eleizgizon gehienentzat tesi ha sublebazino garbia zen eta baseko zenbait abade eta fraile aurrerakoirentzat be ez zen irunsterreza. Gotzainak laster abiarazo ebazen neurri diziplinarrak. Lehenik, berak pertsonalki egingo eustan azterketa bat, moralari eta zenbait gai teologikori buruz. Barria oso pozik hartu neban, kontradikzinoa nabarmenago bistaratzeko modua ikusi baineban. Argigarritzat azaldu beharra dago abadeok nozik nozera azterketa batzuk gainditu behar genduzela, «lizentziak» geugantzeko, hots, predikatzen, konfesatzen eta abarrean jarraitu ahal izateko. Azterketak gehienean moralari buruz izango ziren, hori baitzen eleiza dominante hari gehien ardura eutsona, eta azterketaren maila edo notaren arabera, urtebete, bi edo luzeenean bosterako lizentziak banantzen ebezen. Abadeak kontroletako sistema



zorrotz bat. Epea amaitutakoan, azterketara aurkeztu eta gainditu ezik, ez zegoen predikatzeko eta ez dakit zenbat abade-eginkizunetarako baimenik. Nik ez neban ganorazko azterketarik sekula egin. Lehenengo deialdian, talde handi batek euskeraz egitea planteatu genduen, bestela ez ginela aztertuko-ta. Arduradunak ezin eban baietzik emon, gora kontsultatu eban eta zenbat eta gorago, nahaste handiagoa sortzen zen. Azkenean dana bertan behera itzita etxeratu ginen, teorikoki lizentzia barik, baina bardin jarraitu genduen geure zereginetan, herriari azalpen bat emonda. Honek gatazka bizitu besterik ez eban egingo, eta halantxe jarraitzen eban kateak, era bateko eta besteko ekintzekin.

Gotzainak berak pertsonalki aztertzea guztiz ezohikoa zen. Gotzaindegitik iristen hasi ziren gutunak bihurtu egiten nebazen, euskerazko azalpen bategaz, alegia, gaztelaniaz zetordan ezer ez nebala haintzat hartzen eta ni jakituntzat gelditzea gura baeben, euskeraz bialdu beharko eustela eta halakoak. Lehenengotatik adierazo neban azterketa egiteko guztiz prest nengoela. Hainbat gorabeheraren ondoren, jarri eusten azterketaren eguna eta ordua. Beste abade lagun batzuri zer egiteko asmoa neukan adierazo neutsen eta talde batek lagunduko eustan Gotzaindegira. Atxurin hamaiketakoa eginda, sosoiko azaldu nintzen Mazarredora, liburuei ezelako begiraturik emon barik, noski, nire asmoa neuk Gotzaina aztertzea baitzen. Ate bat eta bestetan zeremonia guztiak eginda, areto batera sartuazo ninduen, Gotzaina atoan etorriko zela esanez. Etorri zen, bai, eta ez zelanahi.

—¡Hombre, Amuriza! ¡Por fin estás ante tu Obispo!

—Bai, Gotzain jauna. Zegaitik ez nintzen etorriko, ba?

—¡Retírense todos y déjenme solo con este curita!

Niri beheko aulki lerroaren erdian jesarteko agindurik, bera eskenategiko besaulki lujoso batean apaztu zen. Bere jazkera ikusgarriz, luze baino zabalago emoten eban Gotzain txikia oso goi ikusten neban eta suposatzen dot berak ni alderantzizko

distantzia berean kontsideratzeko modua izango zela. Azterketa hastera doala, dinotsot:

—Parka, Gotzain jauna, baina aurretik, berorrek txarto ez baleritxo, papertxo bat irakurri gura neuskio, azterketaren aurre-puntu batzuk azaltzeko. Gaztelaniaz dago eta laburra da.

—¿Otra vez con papelitos?

Ez eustan baimenik emon gura, baina ekin egiten neutson, ahalik apalen, paper ha danen ganetik irakurri gura neutsonda. Azkenean amore emon eban, arin irakurteko aginduz. Papera gaztelaniaz idatzia neukan, euskera-erderen tirabiraz harago, gauza batzuk argi entzun eta uler zegizen gura baineban. Idazki haretantxe zegozen egun haretan egingo nebazen erderazko berba bakarrak. Irakurten hasi nintzeneko, Gotzain txikia bere bésaulkian bihurritzen eta sumintzen ikusten neban. Ez zen irakurgai luzea, baina ez eustan amaitzeko astirik emon.

—¡Fuera de aquí!

—Eta azterketa, Gotzain jauna?

—¡He dicho que fuera! ¡Fuera! ¡LLévenselo y que no aparezca nunca más por este Obispado!

Gotzaindegiko kanonigoak eta idazkariak ikaraturik sartu ziren, zer ezbehar ete zen. Gurpide txikiari txinpartak zeriozen. Penagarri da paper ha ez gorde izana, beste asko be gorde ez genduzen lez, baina gitxi gora behera «Zeruko Argia»ko artikuluan azaldutako tesia berari bihurtu neutson, azterketari izatetik salatzaile bilakatuz. Ondo pentsatuak eta neurtuak nebazen berbetan, eleizaren ebanjelioagazko traizinoa arpegiratu neutson, liturgiako hizkuntzaren arloan konkretaturik. Lizentziak kendu arren, neure abade lanetan bardin jarraitu neban eta kontradikzinoak areagotu besterik ez ziren egingo. Eleizarentzat ez zegoen konbertsino posiblerik eta Euskal Herriaren bizkundea ez zegoen gelditzerik. Beraz, ez zegoen erremediorik.



Papertxo ha ez gordetzea penagarri izanik, penagarriago jat gertakari haretaz jarri neban bertso sorta galdu izana. Dozena bateko sorta izango zen, zortziko txikian. Abade batzarretan eta Herri Gaztediko bileretan hamaika bider kantatu nebazenak, gero urteakaz zeharo ahaztu jatazen. Beharbada nonon grabaturik geldituko ziren, baina nork jakin. Ahaleginak eginik, oso zati txiki, ia ezerez batzuk gogoratu dodaz, baina ezin dot ezelan be kondairaren haririk berregin, memori zulo guztiak harraskatu arren. Lehenengo bertsoa, adibidez, «bertso barri batzuek» hasiko zen, baina ez dakit jarraitzen. Beste bat hasten zen: «Atxurin egin neban / hamaiketakoa». Beste bat: «Mazarredora heldu / ta ate ondoan / Gorosarri zala-ta / bat hantxe zegoan». Gorosarri hau kanonigo zorrotzetako bat zen, ikaragarrizko surra zeukana. Hortik gogoratzen dot beste puntu bat: «surra okozpeagaz / egina dau junta». Beste baten amaiera: «han geratu zan gure / Obispo txikia». Horretantxe amaitzen da nire memoria. Bertso sorta osoa berreskuratzearren, zeozer emongo neuke, oso istorio adierazgarria eta pertsonalki intentsoa izan baitzen, era barregarrian kontatua. Eta bide batez abadetza librean jarritako sorta bakarrak (bizitzako laugarrenak) zelako bertsokera zeukan ikusiko neuke.

## Mendexako Santa Luzia

Urte batez, Mendexako Santa Luzian sermoia egiteko deitu eusten. Mendexarrentzat egun handia izaten zen eta, Lekeitiotik hur egonik, jente asko batzen zen Santa Luzia eguneko mezan. Baldintza bat ipini eusten. Aurreko urteko sermoilariak, fraile pasiotar batek, sermoia bertsotan egin ebala eta nik be halantxe egin behar nebala. «Hori baino ez bada!». Baietz esan neban. Bertsotan egiteak esaldiak errimaturik jaulkiz joatea esan nahi eban, halako luze-labur baten barruan. Esate baterako:

—Aitaren eta Semearen / eta Izpiritu Santuaren / izenean.

Amen!» (Hau berez be errimaturik zetorren, etenak eta intonazinoa behar den tokian egin ezkero). Neure entzule bihotzekoak / etorriak eta etortzekoak. / Gaur dogu Santa Luzia eguna / Abenduaren hamairuak dakarskuna. / Mendexako Santa maitea / zabaldu eiguzu zeruko atea / edo eskatu egiozu Jaungoikoari / zabaldu daiskun ate eder hori. / Gure zaindariaren dohai gozoak / orain goratzen ditu herri osoak / baina badakizue zer ankerki hil eben / begi biak etara ondoren / danen aurrean eta plaza betean / oinazezko zizpuruen artean. / Begiak atara eutsoezan / eta haren fedea argitu zan. / Orduantxe ikusi eban Jaungoikoa / bizi guztian hain maite izanikoa»...

Eta honelaxe gitxi gora behera, batzutan binan errimatuz, edo, ondo bazetorren, hirunan zein launan, neurtzeko obligazino barik, eta, nahi bazen, jauzi oratorio errimabakoak tartekatuz. Berba baten, norberak gura eban moduan. Errimak eta esaldien luzera gitxi gorabeherakoak bertsotan aritzearen sentsazino osoa emoten eban eta horixe maite eben, antza, Mendexako euskaldunek, aurreko urteko fraileak erakutsi ebanez. Ez jatan hain gatx begitandu eta, izan be, ez dot uste gatxa danik. Artean baneban bertsolari fama eta Santa Luziako entzuleen artean bazen halako espektazino bat, ea fraileak bestean, antzean ala hobeto egingo ete neban. Sermoilari ona, hizlari ona lez, euskaldunek (eta nork ez?) oso estimatua izan da beti, zena zelako edukia zeukala. Areago ondino, jaietan eta eleizkizun handietan batez be, edukiari jaramon handirik ez jakola egiten esango neuke. «Sermoi ederra benetan!» esanez eleizatik urteten ebenei «zer esan dau?» itaundu ezkero, batek baino gehiagok erantzungo eban: «Ez dakit, baina ederra izan da».

Hasi nintzen Santa Luziaren sermoia egiten eta oso errez zetordan dana. Entzuleak begi-belarri zegozela nekusen. Banaka batzuk itxaroten eben, jakinean baitzegozen, baina gehienak ezustean aurkitu ziren. Minutu batzuk erretolika konplazent haretan neroazela, barruan har bat hozka hasi jatan, geroz erasotiago eta mingarriago. «Baia zetan habil? Ze teatro eitten habil, hainbeste geuze esateko ta esan biherreko eukitte? Jainkoan berbien tribunie heure buruen luzimentureko hartu bi'hok? Herri zapaldu baten belarrijjek formalismoz bete bi'hozak?». Honelako pentsakizunak arrapaladan zetordazen, ganezkatu ninduen eta lotsatu egin nintzen, zer ekitaldi zentzunbagea antzezten ari nintzen konturaturik.



—Eta orain, bertsogintzaren lumaje bistosoa albora itxita, parkaidazue hirulau gauza argi eta biluz esatera joten badot. Begiak etara eutsoezen Santa Luzia dogu ikusmenaren zaindari. Zer ikusteko? Zetako daukaguz begiak? Albora bueltetako? Zer da benetan ikusi gura doguna?...

Sermoiari bat batean honelako biraldia emon neutsonean, aurretik ezustean zegozenak, ondoren ikaratu egin ziren, hain gartsu, ia amorruz jarraitu baineban azalpena. Ez neban beste munduko gauzarik esango, gerrosteko tunel luzetik barriro argia ikusten hastea erabagi eban Euskal Herriaren oinarri-oinarrizko egiak baino. Euskal Eleiza, euskeraren eskubideak, herrien eskubideak, errepresinoaren salapena eta horrelakoak. Baina orduan egia bildurgarriak ziren, eleiz plataformatik bakarrik esan zeitekezenak, berehalako errepresalia barik. Kristinaurik gehienek aldi berean pozik eta bildurrez entzuten eben eta halantxe esan eustan Mendexar batek meza ostean, isilka: «Egijjek esa'ozuz, baiña honeik abadiei be ezteutse parkatzen gero!». Horretaz jabetzen ginen eta bagenkien eleizatik zetorkun inpunitatea (poliziak ezin eban legez eleiz egoitzarik indarrez hartu edo eleizgizonik atxilotu, gotzainaren baimen barik) laster amaituko zela. Santa Luzia haretan pozik nengoen sermoia garaiz rektifikatu nebalako. Gehiago ez neban eleizan bertsoak exhibitzeko tentazinorik izango eta inoz eskatu eustenei zalantza barik erantzungo neutsen: «Sermoia egia predikatzeko eta guzurra salatzeko da. Bertsotarako plaza dago». Eta horixe egin neban Santa Luziako meza ostean, ermita aurreko hamaiketakoan bertsoak kantatuz. Abadetzan, hatarako beren beregi deitutako saioetatik kanpora, inoz egiten ez neba-

na egin neban, apur bat erronka gisan. «Bertsolarijje biher b'o-zue, ointxe ikusiko'zue bi'den lekuen. Ia igezko sermolarijjek hau eitterik badekon». Iluntze haretan asaskuan etxeratu nintzen Mendexako Santa Luziatik.

## ABADETZAKO BERTSO IBILERAK

Nire abadetzako bertso plazak, danak batera be, ez ziren hogeta hamarretik gora izango. 1966ko San Isidro egunean, maiatzaren 15ean, debutatu baneban, 1969ko maiatzaren 30ean espetxeal-di luzerako ezkutatu nintzen. Hiru urte justu, beraz. Urtean batez-beste hamar bat saio egin izango nebazen? Orduan, Bizkai alde-an behintzat, ez zen saio askorik ezagutzen eta egiten zirenak uda partean. Domeketan neure abade lanakaitik ezinezkoak kendu-ta, zenbat plaza izango ziren, ba? Aproba dagidan zenbat dator-dazen gogora: Gizaburuaga, Amoroto, Aulesti, Munitibar, Gerri-kaitz, Lekeitio, Bedaru, Kanale, Oromiño, Berna, Gerea, Larrus-kain, Lauroeta, Ipinaburu, Abadiño, Apata, Markina, Berrizko San Pedro Txiki... Gipuzkoan bakarra, Aizarna. Leku batzutan bi edo hiru bider kantatu baneban be, ondino hogeta hamarre-rako asko falta dira. Batzuk ahaztu jatazela emonik, hortxe-hor-txe ibiliko da nire abadetza osoko plaza kopurua. Gehienean Abel Muniategi izango neban lagun. Balendin Enbeitagaz behingoa daukat gogoan, Munitibarren. Arregi eta Mugartegigaz behin edo behin egokitu nintzen, Abel Enbeitagaz... Orduan dagoeneko faman ziren Azpillaga eta Lopategigaz ez daukat gogoan sekula kantatu nebanik. Honeik beste orbita batean zebizen. Nik ez neban neure burua maila horretan ikusten.

Uztapide Ariatzan ezagutu neban lehenengoz hurretik. Ez dakit nor eban lagun edo lagunak, baina gogoan daukat zelan neu be inguratu nintzen, han zela jakinik. Bazkal aurrea edo ostea izango zen, mahaian gogoratzen baidot. Bazen han bertsolari ize-neko ugari eta, Uztapide entzuteko eta ezagutzeko gogoak eroan ninduen arren, bertsoren bat edo beste kantatu behar izan neban, ez larritasun gitxi kostata, halako izen miretsi baten aurrean.



Lazkao Txiki estudiantetan ezagutu neban, Bizkaiko eta Gipuzkoako abadegai eragin samarrek Lazkaoko komentuan egin genduzen jardunaldi batzutan. Arrastirako, solas gisan, Lazkao Txiki konbidatu eben eta han etorri zen bera, gero eta beti eza-gutu neban baizen lagunkor eta artista. Haregaz be bertso batzuk kantatu nebazen, arnasa ondo estututa.

Abadetzan urtebete edo neroala, Bizkaiko txapelketako epaimahaira deitu eusten eta, lan begikoa ez neban arren, onar-tu neban, baten batek egin behar ebala eta itxuran egin neikee-la usterik. Ez daukat, halan be, gomuta zehatzik. Finalerako epai-mahaian bakarrik egon nintzela uste dot. Bakarrik gogoratzen dot argi, lehenengo bien artean Abel Muniategi pasatu ez gendue-lako, gero txosten luze bat bialdu nebala Euskaltzaindiko batzor-dera, zeinaren buru Joan San Martin zela uste dodan, Abelek aurrera pasatu behar ebala arrazoituz. Horrexegatik daukat gogo-an. Finala Durangon izan zelakoa daukat, ez dakit non ziur. Epai-mahaian, Alfontso Irigoien ohiko aurkezle eta antolatzaile nagu-siaz ganera, nortzuk gengozen ez daukat argi. Bat San Martin izan-go zen, Aita Martzel Andrinua... Ez dakit. Horrek esan nahi dau lan harek ez eustala marka handirik itzi. Batzutan epaimahaian egon ete nintzen be dudan jarten naz eta, aitatu txostenagaitik izan ez balitz, dagoeneko zeharo ahaztua nengoke segurrenik.

## XALBADORREN EPAILE

Betiko marka sakona itzi eustana Euskal Herriko txapelketa nagu-siko epaimahaiko egitea izan zen eta motibo nabarmenez: Xal-bador txistukatuaren epaile izan nintzen. Txapelketa nagusiak errespeto handia emon arren, ez neutson lanari bildurrik. Gipuz-

koako bertsolarien hizkera ondo ulertzen eta menperatzen neban eta, bestalde, epaimahaiak niretzat aurreko urteetatik itzal handia zeukan. Ohore handitzat joten neban hara deitua izatea. Hona urte haretako epaile zerrenda: Antonio Arrue, Fernando Artola «Bordari», Jose Maria Satrustegi, Juan Mari Lekuona, Mixel Itzaina, Emile Larre, Mariano Izeta, Anbrosio Zatarain, Zepai bertsolaria, Antonio Zabala, Aita Martzel Andrinua, Xabier Amuriza eta Alfontso Irigoien, hau gai jartzaile eta aurkezle. Artxibora begitu barik ez neban inondik be hirulau izenez gorako zerrendarik etarako.

Langintza haretatik, Xalbadorrenaz ganera, gauza bi dodaz gogoan batez be. Alde batetik ohartu nintzen Iparraldekoei, Xalbadorri eta Mattini, oso gitxi ulertzen neutsela. Iparraldeko literatura eta bertsogintza (Etxahun eta Elizanburu batez be) irakurriak eta ikasiak nebazen arren, bat-batean harein aurrean hutsean aurkitu nintzen. Ez baita bardin literatura idatzia eta ahozkoa. «Oso gitxi» esapideak ez dau, noski, hutsaren hurrengoa esan gura. Lexiko eta esamolde, bertso batean ehuneko hogeta hamar bat (zifra bat emotearren) ulertu barik gelditzea oso gitxi ulertzea da, portzentaia horrek bertsoaren osotasun guztia harrapatzen baitau, batez be ulertu bako berbak eta esaldiak bertsoaren gune garrantzitsuetan datozenean. Iparraldeko euskera idatzia ikasia neban, baina ez nengoen entzuten ohitua eta gitxiago bat-batean eritxi bat emoteko moduan.

Oso gogoan gelditu jatan beste gauza bat da zelan puntuatzen genduen, mahaian lerroan jarrita eta alkarri begituz. Nik behintzat halan egiten neban neure ondokoakaz eta honeik nigaz. Zelanbait esateko, nota adostua emoten genduen. Horrek alde batetik diferentziak leuntzen ebazen eta beharbada objektiboago izan zeitekeen, baina sakonean, nire kasuan behintzat, segurantzarik eza esan nahi eban. Bakotxaren erantzukizuna danen arteko erabagian ezabatzen zen. Harritu nintzen zelan epaile batzuk oin zerrenda osoak zeroezen, zorioneko potoaren bila. «Lan mekaniko hau batek eindde ez ete litzakek nahikoa?», pentsatu neban, baina ez dakit neu be, besteak ikusita, oinak idazten ez nintzen hasi. Puntuaketa bistan emoten genduelakoa daukat, nonoz halan egin izana baitaukat gogoan, baina ez nago ziur txapelketan ala hurrengo urteko sariketa nagusian izan zen.



## XALBADORRI TXISTUAK

Ahaztuko ez jatana Xalbadorri jotako txistualdia da, eta unea bera baino ia gehiago esango neuke, handik egun batzutara, txapelketako liburua eskuetara iritsi eta irakurri ondoko zauskada. Has gaitezen egunetik bertatik. Uztapidegaz txapela jokatzeko, Alfontso Irigoienek aurrerako Xalbador iragarri ebanean, eromenaren eztanda bat izan zen. Ketan lanbroturik zegoen pilotalekuak basatxakurren kaiola handi bat emoten eban, danak uluka eta txistuka. Danak ez ziren aktiboak izango, baina halan emoten eban. Batzuk Lazkao Txiki pasatzea gura izango eben, beste batzuk Lopategi, baina Xalbador ez zen, antza, inoren gogoko. Epaimahaikook, nik behintzat, ez genkien burua non gorde, txistu hareik gure erabagiaren aurkako hasarretzat hartzen baikenduzen. Eskerrak behinolako Udarregiren «kuadrila fuertea» gengozela, bertan lintxatuko ete ginduezen pentsatu baineban.

Larriena, halan be, Xalbadorrena zen, bera baitzegoen bitartean. Denpora aurrera zihoan eta Irigoienek Uztapideri agurra kantatzeko eskatu eutson, ea honen itzalak jentea isilazoten eban, eta halantxe gertatu zen. Harritu ninduen eta beti harritu izan nau Uztapidek zelako agur topikoa kantatu eban, ezer gertatzen ari ez balitz lez. Harek amaitutakoan, Xalbador mikrofonora hurreratu zeneko, aurreko eztanda indartsuago barritu zen. Xalbadorrek pare bat urrats atzerantz egin ebazen eta hantxe jarraitu eban entzuten eta ikusten, bertsolaritzaren historian gertatu den lotsagarririk handiena. Minutuak, minutu eternoak, aurrera zihoazen eta ez zen eskandalu ha atertzeko biderik agiri.

Xalbador alboz ikusten neban eta haren perfila begietan itsatsita gelditu jatan, bekainak jausita be derrigor ikusteko moduan. Eskuak atzean, gorputza arean albokera, apalmena zein erdeinua adierazo zeikeen inklinazinoan, sorbaldak simetria abandonatuan eta burua gorantz eginean, begirada maldezinoaren sorbururantz. Txapel hegal-mardula, buru ganean egoten nekaturik, osterantz jausi guran ikusten neutson, nire aldeko belarria nabarmenki bakar itzirik. Arpegian sur gotor batek ekatxari aurre egiten eutson, doi bat ezpanetarantz tiratuz, nonon ezkutatu behar bazen. Nozbehinka burua mikrofonoaren oinerantz makurtzen ebanean, begiradak oso alborantz eskapatuko eutson, epaimahaikoai «zer egin duzue» galdetzen lez, edo pilotalekuko aterantz ihesi, edo amorruaren norabide frontala ekidin nahian, entzuleakanako higuinagaz topo egitea saihesteko ez bazen. Gizonak oso galdurik edo erabat burgoi egon behar dau, bere aldetik ezeren erru bako infamia bati aurrez aurre begitzeko. Nozbait, nozbait zazpi minututik gora (zazpi minutu eta lau segundo justu) halako egoeran denpora infinitua baita, entzule batzuk isiltasuna eskatzen eta txaloak joten hasi ziren, oholtzako bertsolariak be Xalbadorren alde mogitu ziren eta apurka-apurka, txaloak gehituz txistuak gitxituz, kantatzen hasteko moduko baretasuna egin zen, ez osoa halan be. Xalbadorrek bertso famatu hau kantatu eban:

*Anai-arrebak, ez, otoi, pentsa*
*neure gustura nagonik*
*poz gehiago izango nuen*
*albotik beha egonik.*
*Zuek ez bazerate kontentu*
*errua ez daukat, ez, nik...*

Hemen entzuleak txaloka hasten dira eta ezin dau jarraitu. Alditxo baten ondoren, holan amaitzen dau:

*Zuek ez bazerate kontentu*
*errua ez daukat, ez, nik*
*txistuak jo dituzute bainan*
*maite zaituztet orainik.*



Halantxe emon eutson barruak «erdeinagarriak zarete» esateko erarik eleganteena. Bertso honek eragin eban txaloaldian aurreko txistuzale askok parte hartu eban eta entzuleen bihotz «jatorraren» erakusletzat kontatu ohi da, baina, buruz begituta, are gatxago egiten da bertsozale harein jarrera ulertzea. Gatxago eta erdeinagarriago. Zelan pasa daiteke hain denpora laburrean gatxespen ankerretik onespen zintzora, danak mozkortuta ez bazegozen? Zeitekeena hau be, garai haretako bertsozale gizonezkoek bazkal ondoren odola bero-bero ekarten baiteben, eta gauza jakina da horrek burua lainotu egiten dauela, aldi bereko puruek ingurua lanbrotzen daben antzera.

Xalbadorren eta Uztapideren arteko buruz-burukoa egin zen eta Uztapide emon genduen txapeldun. Entzuleek horixe nahi eben eta danak pozik, «ederra izan dek!» hots eginez. Bazen bertsorik onenaren sari bat eta horretan ez genduen dudarik izan Xalbadorri emon behar jakola, ez dakit konbikzinoz ala desiraiñez. Oso gogoan daukat, jaztegietara erretiraturik, erabagia hartzen ari ginela, zelan Itzainak behin eta barriro zinoan bertsorik onenaren sariak irriaren bertsoarentzat izan behar ebala. Ez geuntson jaramonik egin eta alde batetik ulertzekoa zen, txistuen ondorengo bertsoak, ateraldi jeniala izanaz ganera, eguna betiko markaturik itzi baiteban. Dana dala, neu behintzat ez nengoen irriaren bertsoaz jabeturik eta ez neban ulertu Itzaina zegaitik tematzen zen haretan. Baleiteke beste epaile batzuk be nire antzera aurkitzea han, inork ez baiteban Itzainaren proposamena haintzat hartu. Bueltan pozik etxeratu nintzen, egun madarikatu batetik libratu izanaren deskargaz. Xalbador ez neban pertsonalki ezagutzen. Beharbada egun haretan agurtu izango neban pasadan, baina ez daukat gogoan. Haregaz egindako lehen berbak hamar

urte geroago izango ziren, Lazkao Txikiren omenaldian. Ez neban pertsonalki ezagutzen, baina ezin neban Xalbadorren txistu aurreango soslai ha begietatik kendu. Artean plazetan agertzen hasia nintzen eta egun haretan bildurra hartu neutson bertsolari izateari, nahizta nire burutik ez zen pasatu be egiten inoz halako txapelketan jokatzerik. Orduan ez neban susmatzen nire abadetza urte gitxiren buruan norantz amaituko zen.

Ez dakit zenbat egunera, ez askora, Aita Zavalak horretan arin egiten baitebazen lanak, eskuratu neban ikusteko irrika kezkatian nengoen final haretako liburua. Biziro gogoan daukat unea: Gizaburuagako abadetxeko

eskaratz zaharrean, horma kontrako erloju handi eta antxinakoaren aurrean, liburuaren orriak joranez pasatzen hasi nintzen. Minutu gitxiren buruan, hantxe burutuko zen finalean baino zaustkada bortitzagoa. Txistuen arrazoiaz edo desarrazoiaz jabetzeko, arrastiko aurreko saiotik, Itzainak behin eta barriro aitatzen eban irriari buruzko bertsoaren bila jo neban.

A. Irigoien: «Eta azkenez, Xalbador, bertso bi bota behar dizkiozu parrari, irriari».

Xalbadorrek:

*Geure izakera gordetzen degu*
*gizasemek gehienetan*
*arrazoirikan ez izanda ere*
*iduri dugu penetan.*
*Oi, irria, zu bizi huntako*
*beharra zira benetan*
*sor dakigula maiz irri hori*
*beti gure ezpainetan.*

*Irria beti ez ditaikela*



*bihotz barnetikan egin*
*gogorik ez baldin bada ere*
*hori egin daike berdin.*
*Nahiz irria gezurra izan*
*eta berari eman min*
*bederen beti eginen dautzu*
*bere inguruan atsegin.*

Bertso honeik, batez be bigarrena, ulertu baikoz, aulkian josita geratu nintzen. Itzainak arrazoi zeukan. Xalbadorrek botatako bertso jenial askoren artean bakarra hautatzera bortxatuko banindue, beharbada hauxe hartuko neuke. Zelako adierazmen bortitza daukan hirugarren puntuko «nahiz irria gezurra izan eta berari eman min» horrek, azkenean —eta «bederen» —irriaren ondorio ongarria indartzeko. Lehenengo puntu biek kontrastea ezin bikainago abiarazoten dabe. Bertso hau kantatzeko gai izan zenak gero txistuen apalmena jasan beharra irain ikaragarria da. Ni, epaile izanik, ez nintzen zuzenean jabetu. Beste epaileetarik zenbat jabetu ete ziren? Eta batez be txistu joleek zer ulertu ete eben? Egia da bertso batek edo bik ezin dauela sailkapen bat justifikatu, baina Xalbadorrek kantatu eban beste bertso eder ugari. Hona Gorrotxategigaz ofizioan egin eban saioa.

A. Irigoien: «Zuek biok, Gorrotxategi eta Xalbador, senar-

emaztegai gazteak zerate eta, kanta zaharrak dionez, txoriak bere umeak bezela elkar maite dezute. Baina pobreak izaki eta ezin ezkondu zerate. Gorrotxategi izango da senargaia eta emaztegaia Xalbador».

Gorrotxategi: *Ai, andregaia, maite zaitut nik*
*zugana nahi det zuzendu*
*banaka bizi gerade biok*
*horrek pena ematen du.*
*Bostehun peztako jornala daukat*
*ezin gindezke ezkondu*
*lehendabiziko ein behar dana*
*jornal kontu hau konpondu.*

Xalbador: *Gizon maitea, egin zinautan*
*bizi-laguntako mezu*
*geroztik hunat jarria nauzu*
*sekulako zoriontsu.*
*Urrikalmenez betea zira*
*zurea dena dohatsu*
*diruaz ez zaut eni ajolik*
*hoinbeste maite banauzu.*

Gorrotxategi: *Ai, andregaia, sinistu zazu*
*oraingo nere esana*
*bizileku bat erosi ezin*
*hauxen da gertatzen dana.*
*Baino gu horren alkar maitiak*
*ene andregai laztana*
*maitasuna da munduko diruz*
*inoiz ordaintzen eztana.*

Xalbador: *Guretzat dauden zoritxar denak*



*Jaungoikoak badakizka*
*zorionak ta penak berarek*
*banatzen ditu aldizka.*
*Maitasunean balia zagun*
*daukagun dirurik pixka*
*gabeziako ezbehar hoiek*
*eginen tugu erdizka.*

Gorrotxategi: *Konponduko ditugu guziak*
*elkartzen geradenian*
*hemen kontuak alperrik dira*
*denbora ondotik juanian.*
*Ai, andregaitxo, saiatu behar*
*degu guk biok lanian*
*baino bizitza eramango degu*
*alkarren aldamenian.*

Xalbador: *Halere elgar ikus zakegu*
*guk goxoki bekoz beko*
*ez izan arren jateko zerbait*
*eta nahikoa soineko.*
*Diruaren zai gelditzen gera*
*bera etortzen deneko*
*artean biak arkitzen gera*
*maitasunaren meneko.*

Xalbadorren saio hau, oro har, antologikotzat jo behar da. Gaia ohikoa eta ia topikoa izanik, ikusgarria da, batez be bigarren eta hirugarren bertsoetan, bai errimaz, bai ideia kontrajarrien garatzez, bai esapideen edertasunez, zein indar hunkigarria lortzen dauen maitasunaren alde. Hirugarren bertsoaren edertasuna, batez be azken puntu biena, bat batekotasunaren gailurrean be bakantzat jo behar da. Ez beharbada irriaren eta bertso honein maila-

koak, baina «salatzaile bati edo denuntzia sartu duen bati» gaian kantatu eban bakarreko hirukotea oso ontzat jo behar da. Puntuen erantzunak barriz puntakoak izan ziren. Lazkao Txikik eta Lopategik sailkatzeko meritu ugari egin ebela emonda be, eta konparaketa zorrotzetan sartu barik, argi dago Xalbador ez zela hutsean pasatu. Gizaburuagako abadetxeko eskaratz zaharrean bertso honein miresmenak ez ninduen gitxi nasaitu Xalbadorren alde emondako epaian.

## XALBADOR ETA UZTAPIDEREN SAIOA

Harridura ez zen, ostera, abiatu besterik egin, ze Xalbadorrik harrigarriena gero agertu baitzen, Uztapidegaz egindako buruz burukoan. Uztapidek berak be, segurrenik, bere txapelketarik onena orduantxe egin izango eban, baina Xalbadorrena markatik gorakoa izan zen. Badirudi txistuek, amilduazo beharrean, oldartuazo egin ebela. Merezi dau saio osoa emotea. Xalbadorrena puntuatu egingo dot, gertatu zen mirakulura hurreratzen laguntzeko.

Iri.: Joxe ala Manuel
da zure izena?
Uzt.: *Hauxe gauza erantzutera*
*honuntz gatozena.*
*Joxe jarri ziraten*
*kartilan aurrena*
*bainan Manuel danak*
*deitzen diratena.*

Iri.: Negurtu behar dezu



Uztapiderekin...
Xal.: *Gure bien negurria*
*nik aurretik jakin.*
*Halere lankide baitut*
*hartzen dut atsegin*
*gaur ere geldituko da*
*txapela berekin.*

Uztapideren erantzuna bikaina da, hamar puntu emotekoa. Xalbadorrena be oso ona da. Bederatzian izten dot. Ondoren gai bana dator bakarka.

Iri.: «Uztapide, zeharo beltzez jantzitako umetxo bati hiru bertso kantatu behar dizkiozu».
Uzt.: *Hauxen da gaia zaidana neri*
*neregana iritxia*
*bainan halare estutu gabe*
*emango det iritzia.*
*Nere aurrera hementxen dator*
*orain haurtxo bat txikia*
*zerengatikan ote zabiltza*
*horrela beltzez jantzia?*

*Pentsamentuak aitortutzeko*
*zertarako egon lotsez?*
*Hemen daguan haurtxo maitia*
*maite baidut nik bihotzez.*
*Garai batean aingerurikan*
*hola etzan jazten beltzez*
*Gure euskeraren lutua ote da?*
*Enuke esango ezetz.*

*Batzuek azkar samar nolatan*

*zaizkigun jantziz belztutzen*
*bainan neroni berri aldiak*
*sekula etzaizkit aztutzen.*
*Euskera inoiz hilko danikan*
*honek eztu sinistutzen*
*jantzi beltz hori kendu, haurtxua*
*berriz hasi da piztutzen.*

Saio hau beharbada gaur ez litzateke asko puntuatzekoa izango, baina garai haretan Uztapidek jakin eban hari bero bateri heltzen eta sasoian sasoikoari bere balioa autortu behar jako.

Iri.: «Xalbadorrek beste hiru bertso, zergatik haurrek, jaiotzen diranean, negar egiten duten esanaz».

Xal.: *Haur maite horrek berak zer daki*
*ez baiterauka indarra?*
*Aingerutxo maite horrek beti*
*dauka lagundu beharra.*
*Bertzerik ezer ez daki eta*
*berak lehenengo negarra*
*maiteak ez derauka pasturik*
*mundu huntako hondarra.*

*Inoiz negarrez haurtxo txiki bat*
*albotikan dut hauteman*
*aitak entzun ez zezan gero du*
*amak gelarat ereman.*
*Oi, haur maitea, hasi parrez zu*
*ez, ba, negarrari eman*
*nahiz ez jakinean zaudela zu*
*negarraren erresuman.*

*Haurtxoa sortu den ordurako*



*heltzen dio negarrari*
*bera pozetan balin bada ere*
*lanbide horri da ari.*
*Zeren Jeinkoak bere jaiotzan*
*errana dion haurrari:*
*gure mundu hau tristea dela*
*benetako negargarri.*

29 puntu (9-10-10). Bakar saio hau Xalbadorren antologikoetakoa da. Lehen bertsoan, hasierako galderaren espektazino indartsuak eta amaieraren iradokipen gordinak ez dau geroko bietan huts egiten. Bigarrenean, lehenengo puntu bietan deskribapen hunkigarria egin ondoren, haurrari «hasi parrez zu» eskaturik, alderantziz eta zeharkara adierazoten dau negarraren arrazoia «negarraren erresuma» dela, haurraren «ez jakinean» horrek hunkigarriro indartua. Hirugarren bertsoa, barriz, direktoa eta jeniala da. Zein fatalismo bortitza jarten dauen Jainkoaren ahoan!

Iri.: «Orain ofizioa emango diegu Uztapide eta Xalbadorri. Biok anaiak zerate. Zu, Uztapide, egunsentian lanera zoaz eta zu, berriz, Xalbador, gaupasa eginda, ordu berean etxera zatoz eta topo egiten dezute. Alkarrekin teman hiruna bertso».

Uztapide:
*Anai maitea, entzun itzazu*
*beste anaiaren esanak*
*gure aurreko gurasuake*
*etziran hola izanak.*
*Gaur ere eginak izango 'ituzu*
*zuk egun guztiko lanak*
*ama batenak gerade baino*
*ez gera berdinak danak.*

Xalbador:
*Argisentian etxera buruz*
*hartzen detan ahalgea!*
*Eta zu eni hor berriketan*
*ondo jakin gai nerea.*
*Lanera zoaz, gogo baituzu,*
*hola da egun legea*
*bietan errukarriena ni naiz*
*lorikan egin gabea.*

Uztapide:

Xalbador:

*Gure etxian ikusteko naiz*
*oraindik ondoren latza*
*gaur ere nola egin dezun zuk*
*txit erretira narratsa.*
*Dirua hola botatzeko zu*
*etzerade aberatsa*
*ia mesedez esan zaidazu:*
*nun pasa dezu arratsa?*

*Taberna baten egonak gira*
*auzoko Anton ta biak*
*eta gero hor konturatu gabean*
*atzeman gaitu argiak.*
*Zuazi lanerat,nik instant batez*
*itxi behar tut begiak*
*atzartzeaikin moldatuko tut*
*txerriak eta behiak.*

Uztapide:
*Denbora bazan hor ibiltzeko*
*goizetikan arratsera*
*Anjelusian mutil jatorrak*
*etorri behar du etxera.*
*Orain sasoia hola galduta*
*gero bazuaz zahartzera*
*gauza onikan ez da zurekin*
*mudatutzen ez bazera.*

Xalbador:
*Mundu guzian zabaldua da*
*lagun zalea naizena*
*nik lagun bila natorrenean*
*harrapatzen dut dozena.*
*Eta zu berriz lanetik laister*
*etxera zuzen zuzena*
*aintzina ere jarraituko zaizu*
*Manuel Tonto izena.*

Saio honetan Xalbadorri 25 puntu (8-9-10) emoten dau-tsodaz. Bigarren bertsoa meritu handikoa da. Lehen puntuetan erantzun zehatza damotso Uztapideren itaunari eta bigarren par-tean ezin dotoreago garatzen dau bere arrazoia. «Zuazi lanerat, nik instant batez / itxi behar tu begiak» hori ironiaren eta ele-gantziaren konbinapen xarmanta da. Hirugarren bertsoak, barriz, agiri-agirian daukaz bere dohaiak, puntuazinorik gorena mere-zitzeko. Ondoren bertso guztiak, hamaika, kartzelako lanak dira.

Iri.: Pestarik behar bada



bego Donostia...

Uzt: *Askok botatzen dio*
*honeri begia.*
*Ni're hortako nitzan bai*
*goizian jaikia*
*ez al da ba herri hau*
*oso egokia?*

*Xal: Hunat etortzeko beti*
*bada aitzakia.*
*Ta euskandunarentzat*
*leku egokia*
*hemen euskarak badu*
*bere berokia.*

Iri.: Euskaldunon arnasa
izan da euskera...

U: *Momentu honetan gu*
*ederki ezkera.*
*Lehenago goian ginanak*
*egin degu behera*
*etorriko al da laister*
*indartzerko era.*

X: H*ori on ez izaitekotz*
*anaiak ezkera.*
*Beti jarraitu dezala*
*gaurko erabera*
*ikusten det ez doala*
*oraindik gainbehera.*

Iri.: Zerraldoan dijoanak
«gero arte» dio...

U: *Gaizki gelditu naiz gaur*
*hau dala medio.*
*Ez baidet entenitu*
*ta honek zer dio?*
*Oso zuzen ai naizenik*
*enago ni pio.*

X: *Zure esanak,Alfontxo*
*jarri nau serio.*
*Jendea tristatzen da*
*hau dela medio*
*sortzeak hiltzea du*
*beti ondorio.*

Iri.: Pakea nahi degu ta

ez gerrarik hemen...

U: *Hortan badadukazu*
*aizu, zerbait kemen.*
*Orain hor ibiliak*
*Dira Israelen*
*bertan egin dedila*
*gerra honek amen.*

X: *Pakezaleak mundura*
*gu jaioak ginen.*
*Orainik guk daukagu*
*gudua eremanen*
*bakeak luzi beza*
*beti han ta hemen.*

Lau puntuon erantzunetan Xalbadorri 31 (8-7-10-6) puntu emoten dautsodaz. Bere hirugarrena antologikoa da. Ondoren lau oinak emonda, zortziko txikia osatzeko.

Antza, dantza, arrantza, esperantza.

U: *Izan nahi baldin badegu*
*euskaldunen antza*
*beti librian egin*
*bihar degu dantza.*
*Aspaldian ni ez naiz*
*juaten arrantza*
*baina gaur arratseko*
*badet esperantza.*

X: *Hemen jendeak dauka*
*itsaslari antza*
*iduri du barruan*
*daukala arrantza.*
*Gazteak aunitz maite dute*
*jolas eta dantza*
*hortarikan badute*
*zerbait esperantza.*

Inor, gogor, jator, bizkor.

U: *Hemen minberatzia*
*ez da komeni inor*
*horregatikan ez naiz*
*aiko oso gogor. s*
*Beti portatutzia*
*gustatzen zait jator*
*aguro hasiko naiz*
*ta bukatu bizkor.*

X: *Neure ustez lanean*
*jokatu naiz jator*
*jakinduri gutxi baina*
*olasetan bizkor.*
*Txistu jotze,hargatikan*
*atzeman dut gogor*
*ni baino tristeagorik*
*ez du jarri inor.*

Lau oineko biotan Xalbadorri 13 (4-9) puntu emoten dau-



Lau oineko biotan Xalbadorri 13 (4-9) puntu emoten dau-tsodaz. Lehenengoan, biena be txartzat jo behar da, lau oinegaz argumentu bakar bat burutzerik be ez baitabe lortzen. Ideia lotubakoak eta biak merkeak. Xalbadorren bigarrena, ostera, oso ona da. Ondoren bakar gaiak, bina eta hiruna bertso botatekoak.

Iri.: «Ijito mutil gazte bat zuk dirua daukazun Bankuko kobradore izendatu omen dute. Zer deritzazu? Bi bertso».

Uztapide:
*Zer triste nagon ezin sinistu*
*leike neronek esanda*
*oraintxe ere milagro ederra*
*gure tartian izan da.*
*Gure Bankuko kaja horretara*
*ijito txar bat juan da*
*akabo nere diru pizarrak*
*lehenago gutxi nuan-da.*

*Lehenago ere pasatua naiz*
*hamaika horrelako gai*
*ta zelebre bat hartzeko hemen*
*nengon oraintxen ere zai.*
*Ijito hori horruntz sartu da*
*ta beti egingo du jai*
*eskolarikan ez du jakingo*
*dirua harrapatzen bai.*

Xalbador:
*Aizu, Alfontso, ni ez nezazu*
*zure gai txarrekin ito*
*ni menperatu beharrez hemen*
*aria zira askito.*
*Gauzak horrela direla bainan*
*ni ez naiz horrekin kito*
*dirua irabazlea ni ta*
*haren jabea ijito.*

*Narras kusten nik hortan ere*
*gaur naguen ingurua*
*ez dago hain leitu erreza*
*mundu huntako liburua.*
*Ijitoa jabe jarri da*
*nekatu gabe burua*
*esku onetan eroria da*
*gaur Xalbadorren dirua.*

Xalbadorri 13 (6-7) puntu emoten dautsodaz. Puntu dotore bat edo bestez harago (Uztapidek «akabo nere diru pizarrak lehenago gutxi nuan-da» eta «eskolarikan ez du jakingo, dirua harrapatzen bai», Xalbadorrek «esku onetan eroria da gaur Xalbadorren dirua»), bai bataren eta bai bestearen bertso honeik ez dauke zer puntuatu handirik.

Irigoien: «Eta azkenez hiru bertso oheari, ohatzeari».

Uztapide:
*Nere lanetan pasatutzen det*
*urte guzian eguna*
*baina oiera juan beharra*
*etorritzian iluna.*
*Nekatutako gerriarentzat*
*huraxen gauza biguna!*
*Bedeinkatua izan dedila*
*oia, zu egin ziñuna.*

*Aldrebes edo ongi esaten*
*jarraituko det lanian*
*ona zerala lehen esan degu*
*segituko det lehenian.*
*Behin juan ezkero luzaro enaiz*
*egoten aldamenian*
*jaian parranda egin eta hor*
*gozatu astelehenian.*

*Nere oraingo hiru bertsotan*
*oiaren kontua dabil*
*badakizute ni erdi gaixo*
*eta naguala debil.*
*Bere aurrian aurkeztutzen naiz*
*eta jarriko naiz umil*
*oi zuri baten jaio nitzan da*
*oi zurian nahi nuke hil.*

Xalbador:
*Ohea bezain zer baliatzen*
*ote da gure bizitzan?*
*Leku pausakor hobeagorik*
*nehon ez ditaike izan.*
*Handik kanpora ertetzen gira*
*eginbeharren peskisan*
*astia izanez goizean ere*
*gehiago egonen nitzan.*

*Ohe maitea zurekin badut*
*nik egundainoko hartze*
*nahiz artetan ematen duzun*
*kolpeño bat edo bertze.*
*Bizitze onik zu gabe ez da*
*hortaz beti dut aditze*
*ez zeradea zuhaur izan zu*
*maitasunaren ohantze?*

*Ohe gaixoa, zu maitagarri*
*zutaz ez nitaike ixil*
*zutaz behartu gabe egun bat*
*munduan ez daike ibil.*
*Denak horrarat datoz azkenian*
*izanikan ere abil*
*zutan sortu ta zutan haziak*
*zutan behar dugu guk hil*

Xalbadorri 28 (9-9-10) puntu emoten dautsodaz. Bertso honeitan Uztapideren lana oso ontzat jo zeitekeen, bigarren bertsoa erdi hutsean ez baletor. Betelan arrunta eta ideia be desegoki samarra datorko, lehen bertsoan jarritako espektatibatik kontraesanean. Berez, parranda ondoko astelehenaren gozamena, lehenengo bertsoko egun lantsuen eta gerri nekatuaren ondoren, kontraste bikaina gerta zeitekeen, ahapaldiaren lehenengo hiru puntu betegarrietan bihurgune hori prestatu izan baleu. Azken puntua, «jaian parranda egin eta hor gozatu astelehenian», bala galdu bat lez dator. Hirugarrena bai. Hau bikaintzat jo behar da. Lehenengo puntu bietan entzuleen gogoan ziren bere erreferentzia pertsonalakaz girotze egokia eginik, hirugarren puntuan ohearen aurrean jarrera erreberentziala hartzen dau, laugarrenean erremate hunkigarria emoteko.

Xalbadorren hirukotea antologikoa da, ostera! Lehen bertsoan, itaun baten indarragaz hasita, dotore eta xarmagarri aurkezten dau ohearen izatea. Bigarren bertsoan oheari zuzenean berba egiteak maila indartsuagora jasoten gaitu. «Zurekin badut... duzun... zu gabe... zuhaur izan zu...». Zein iradokior gertatzen den, kontzesiboan bide batez eta zeharka esanda lez, bigarren puntuko «kolpeño bat edo bertze». Kolpeño horiek gaixotasunak izan daitekez edo baita heriotzaren kolpe tragikoak be, baina bertsoaren amairako pentsatua zeukan maitasunaren ideiak esapidea bigunduazoten dautso eta, biguntzean, hots, txikigarria sartzean, ironia minberan irabazten dau. Hirugarren puntuan «hortaz beti dut aditze» betegarri ahultzat jo behar da, gora egiteko unea zetorrenean hain zuzen. Amaiak, ostera, bai ideiaz, bai esamoldez, bai galderaren indarrez, barriro gorenera jasoten gaitu. Hirugarren puntuko ahulgune horregaitik ez balitz, bertso honeri be duda barik hamarreko puntuazinoa emongo neutson. Eta zer esan hirugarrenaz? Honek ederraren eta indarraren osagai guztiak ditu. «Zu maitagarri... zutaz ez nitaike... zutaz behartu gabe... zutan sortu... zutan hazi... zutan hil...». Indar ikaragarria dago garapen horretan, azken puntuan hiru «zutan» biltzen direla. Eta ohar Uztapidek «nahi» dinon lekuan, Xalbadorrek «behar» kantatzen dauela. Ez dago dudarik honek azken fatalaren etorrera bortiz-

kiago adierazoten dauela. Bertso hau da kasu argietariko bat, hama- rretik gorako puntuazinoa beharko leukeena. Hamar jarten dot- gorentzat horixe erabagi dogulako, baina ale jenial honeik ez dai- tekez zenbaki soil batera ekar eta, ekartekotan, molde erabagia hausi eta bildur barik puntuatu behar litzatekez. Zenbat emonda? Hamabi, hamabost, hogei? Ez dakit, baina poto bat, adibidez, hiru puntuz zigortzen bada, jenialtasun bat zenbatez saritu behar da?

Badago beste kontsiderapen bat. Bertsoak banan puntua- tu ohi doguz eta, epaia be bat batean emotekotan, horixe da prak- tikoena. Baina batzutan hiru bertsoek osotasun guztizko bat lo- tzen dabe. Horixe da Xalbadorren oheari buruzko bertsoen kasua. Baita haurrak jaiotzean zegaitik negar egiten dauen gaiari eran- tzunez kantatutako hirurak be. Orduan esan daikegu hirukoteak berak, osotasun gisan, hamar puntuko epaia merezi dauela. Beraz, banango puntuen batuketa soilak baino gehiago izan behar leuke azken emoitzak. Jenialtasunak holantxe konpentsa daitekez, pun- tuaketa gorenaren topetik gora joteko erizpide arriskutsuegian sartu barik. Bat batean epaitzen dauenak, zeozer aparta gertatu dala begitandu bajako, goren puntuazino arauzkoa emon behar- ko dautso, noski, eta, gehiago emon behar leuskiola uste badau, orduan beste bertso batzutan oparoago kargatzea dauka. Esate- rako, puntu baten goran edo beheran dudan dagoenean, gorantz tiratuz. Subjetibismo arriskutsua izan daitekeela? Epailearen lan gehiena ez al da subjetiboa, hots, momentuko balorapen oso per- tsonala? Zeren alde erabili behar dogu eskuzabala, jenialtasuna saritzeko ez bada? Hau berau be subjetiboa da, noski. Batentzat jeniala dena beste bateri beharbada ez jako hainbeste iruditu- ko, gauza asko baitagoz tartean: ideia, esateko era, oportunota- suna, ironia, indarra... Bakotxak bere irudipenetik neurtu behar dau eta, akatsa edo hustasuna zigortzeko bildurrik euki behar ez bada, askoz gitxiago jenialtasuna saritzeko, horixe baita txa- pelketa batek emon daikeen ekarpenik onena.

Kontuak kontu, Uztapideren eta Xalbadorren buruz buru-



ko lehian kantatutako hamazortzina bertsoetan, Xalbadorren balo- rapenak 150 puntu urteten daust, zenbat epaile izan, hainbeste- tan handitu beharko litzatekeena. Txapelketa honetan hamairu izan ginen. Nire batez besteko puntuaketak 150 : 18 = 8,33 emon daust. Kasu honetan esan beharra dago emoitza mekaniko hau zekenegia dela, ahulguneek batezbestea zorrotzegi jasten dabe- lako, lau oinak emondako bertso kaxkar haretan lez. Zer ardura dabe apalgune batzuk, osoan gailur kate miresgarria agiri bada? Horixe da Xalbadorren saio honetan gertatu zena. Gailurrak hain dira asko eta nabariak ze, bitarteko hutsarte banakak osotasune- an ezabaturik geratzen dira. Saioa begirada bakarrean, hots, osoan hartuta neurtzera jo ezkero, ez daukat dudarik batezbesteko meka- niko horrena baino askoz gorago baloratu beharko litzatekeela. Hamazortzi bertsoak honela puntuaturik geratu dira: 5ek 10na puntu; 6k 9na; 2k 8na; 2k 7na; 2k 6na; batek 4. Ken daiguzan pun- tuazinorik gitxieneko hirurak eta 134 : 13 = 8,93 urtetan dau. Hamazortzitik hamabost bertsok ia bederatziko batezbestea! Ken gitxieneko bostak eta 120 : 13 = 9,23. Hamazortzitik hamairu ber- tsok bederatzitik dezente gorako batezbestea!! Ken zazpi apa- lenak eta 104 : 11 = 9,45. Hamazortzitik hamaika bertsok ia bede- ratzi t'erdiko batezbestea!!! Ez daukat interjekzinoak gehituz eto- rriaren lotsarik.

Baten batek pentsa leike: «Orduan zer dinok? Bertsoak banan puntuatzea ez dela sistema zuzena?». Astiro! Berari ez dago- kon ondorio gratuitorik inok atara ez dagian, banan-banango sis- tema zuzentzat daukat kasurik gehien-gehienetarako. Hemen ez nabil mediokritateak erreskatatzen (horreitan huts egin arren, ez da ezer galtzen), ezta «saio on bat» edo «oso on bat» esan ohi dire- nak baloratzen be. Guztiz mehatz gertatu ohi diren salbuespen jenialez dihardut eta, beraz, balorapenok ez beitez behar ez diren komenentzietara estrapolatuak izan.

Uztapideren saioaren puntuaketarik ez agertzea erabagi dot, bataren gorapena bestearen beherapentzat hartua izan ez dai-

ten. Nahikoa da esatea markagailuan diferentzia handi samarrak urten daustala Xalbadorren alde. Beharbada puntu batzuren goran edo beheran tematu ahal izango da, baina, saioa minimoki ulertuta, argi dago egun haretako galaxia Xalbador izan zela. Ez dot neurtu txistuen aurreko lanak sailkatzea merezi izan ebanetz, nahizta bertso bikain ugari, batzuk antologikoak, kantatu ebazela aitatu dodan, baina, apalmen ha iruntsi ondoren, ez daukat ezbai izpirik txapel jenial bat irabazi ebala, segurrenik inoz irabazi den argiena. Egun haretan neurritik gorako bertsoak ez ebazen bat edo beste kantatu, sortaka eta dozenatik oso gora baino. Noz gertatu da horrelako mirakulurik? Zer izango zen, Xalbador txapeldun erabagi bagendu?

## TXIRRITAREN TXAPELA

Balorapenek, zuzenek nahiz okerrek, zabaltzen diren moduan korritzen dabe eta Txirritaren 1936ko txapelari buruz be sinestu izan da zaharrarren edo errespetuarren emon eutsoela lehenengo saria. Ni behintzat halan entzuten ohitua nengoen, nondik edo zein arrazoiz inork sekula argitu barik, belarriz belarri etorri ohi diren bueltako kanpaien antzera. Uztapidek bere «Lengo egunak gogoan» liburuan kontatzen dau epaimahaiko batek zelan esan eutson berak irabazi ebala eta abar. «Txirrita gizarajoa zaharra dago eta hurrengo urtean etortzeko ere zuk itxura hobea daukazu. Hori urte askotan ezin liteke etorri eta aurten horri ematea pentsatu degu», esan ei eutson epaile batek eta badirudi bertsolariak sinestu egin ebala, norbere aldeko egiak errez itsasten baitira. «Bertsolari guduak 1935-1936» izeneko liburuan be, Basarri eta Uztapideren omenez Gipuzkoako Foru Aldundiak 1985.eko abenduan egin eban bigarren argitalpenean, kontrazalak hauxe dino Uztapidez:
«1936an Donostian Bigarren Bertsolari eguna antolatu zelarik, bertsolari gazte bat aurkeztu zen, oraindik lotsati, garaiko bertsolari onenekin batera. Han zen Txirrita haundia ere, bi bastoirekin txit larri, pausorik eman ezinez. Jokatu zen gudua eta haren erabakia ematerakoan Txirritaren aukera egin zuten epaimahaikoek. Besterik gabe onartu ote zen erabaki hori? Onartu bai, baina askotxoren ustea da egun hartako txapela Uztapide gazteak jaso behar zuela. Izan ere, bere bertsolari bizitzaren azkenetan zen Txirrita eta badirudi nonbait, ondo merezitako famari aitormen eginez batetik, eta zaharrari zor zaion errespetuagatik bestetik, egokiago jo zutela epaileek egun hartako txapela Txirritari ematea».



Honelakoak zabaltzeko eta idazteko kuxidadea izan dabenek hoba zeukien bertsoei arretaz begiratu baleutse. Inoz ez jatan bururatuko bertsino hori dudan jarterik, txapelketa haretako bertsoak aztertu ez baneuz, Elhuyarren CD ROM baterako. Orain lasai esan daiket Txirritak merezimentu osoz jantzi ebala txapela eta beste suposamen guztiak maneiu arloteak direla. Bost puntuei oso ondo erantzunaz ganera, saio haretan bertso antologikoak kantatu ebazen gerraren gaian:

*Zenbat errezo egin izan det*
*nere denboran elizan*
*ta pozik nago ikusirikan*
*pakian nola gabiltzan.*
*Ni naizen bezin kobarderikan*
*inor ezin leike izan*
*semerik gerrá ez joateatik*
*mutilzar gelditu nitzan.*

*Asko dirade nai luketenak*
*mundu danian nagusi*
*pakian bizi diran kristauak*
*bere soldadu ta guzi.*
*Horlakuari tira atzetik*
*joan dedila igesi*
*gerra nahi duan gizonak ez du*
*salbaziorik merezi.*

*Okasiua hara jendiak*
*nola gerta litekian*
*hobea degu gerratan baino*
*bizi umore onian.*
*Zenbait bezela ez naiz izaten*
*fondetan eta kafian*
*gerran gosiak baino nahigo det*
*nahikua janez pakian.*

Hirugarren bertsoaren azken puntua bertsolaritzan ez eziki euskera osoan be pentsatu izan den arrazoirik txokanteenetakoa da. Beste guztiok honela itxaron geinkeen kontrastea: «Gerran nahikua janez baino nahigo det gosiak pakian». Beharbada, berak be horixe esan nahirik, neurrira moldatu ezinik edo, alderantziz urten ete eutson? Gatxa da hain arrazoi bitxia deskuidoz sortzea. Lazkao Txikiri be inoz entzun neutson Bizkaiko Busturiko San Bartolome auzoan, ez dakit berak gurata ala gura barik, honelako zerbait: «Gizonaren ogia ez da izerdi hutsetik bizi». Arrazoi honen kakoa espliketan lanak legokez, baina entzule batzuri betiko gogoan geratu jaken. Txirritaren bertsoaren bigarren erdiak noraezean izten zaitu zentzunik osoenaren itxuran eta errespetorik handieneko berbakaz, ze hirugarren puntuan ez dirudi gerra hain gartsuki gorrotatzeko moduko lujuan bizi denik. Ezagutzen dauen bakea ez da «fondetan eta kafian» ibiltekoa, berari gustatzen jakona bestalde. Badirudi beste bake klase bat amesten dauela, baina alperrik gabiz logika egokien bila. Xenpelarren aldrebeskeria bat glosatuz, hemen be esan beharko geunke: «Arrazoi hoien madria nun dan Txirritak bakarrik daki».



1968an zeresan handia emon eban sariketa nagusi bat antolatu zen. Euskaltzaindiaren antolakuntzaz beste zeozer gura eban talde batek, «Onena» pentsuetxearen laguntasunez, Euskal Herriko hamasei bertsolari onenakaz, sariketa handi bat eratu eban, Basarri be lehiara ekarteko ahalegin guztiak eginik. 1962an Uztapidek Basarriri txapela kendu eutsonean, honek txapelketatik erretiratzea erabagi eban. Esan ei eban: «Aurrerantzean Jainkoa bakarrik izango da nire epaile». Handik sei urtera, Basarri be sariketara aurkeztekoa zela entzunik, Xalbadorrek Uztapideri dinotso: «Ez al zuen, bada, erran hartatik aitzina Yeinkoa bakarrik izanen zela bere epaile?». Uztapidek erantzun ei eban: «Ez zian gezurrik esan. Haren Jainkoa dirua dek». Pasadizo hau Mixel Xalbadorri entzuna dot, honi bere aitak kontatua. Sariketa Basarrik irabazi eban, baina saria Xalbadorregaz erdibanatu eben, honenbeste punturen barruan gelditu ezkero, halantxe egitea erabagita baitzegoen. Sariketa haretan be epaimahaiko izan nintzen kanporaketetan, baina final egunean sukar handiz jagi nintzen, «oinetako lur hau jabilt ikara» eta barriro oheratu behar izan neban. Alde batera poztu egin nintzen eta bestera ez nintzen asko penatu.

## ANTOLATZAILE ETA GAIJARTZAILE

Neure burua orduko abadetza eraginean (ez naz ausartzen «iraultzailean» esaten) buru-belarri sarturik ikusi arren, han-hemen egiten nebazen plazetan ohartu nintzen bertsolariaren jarduna, informala izateaz ganera, sarritan oso formalidade gitxikoa zela, ez hainbeste bertsolarien aldetik, plazako baldintzakaitik baino. Bertso saioak ganora gitxikoak iruditzen jatazen. Bertsolariak kantatzen,

batzuk entzun guran, asko inguruan marmarrean, barkilu saltzailetik tiobiborainoko zarata klase guztiak batera plazan eta han, baztar batean edo erdi erdian, erdirago eta okerrago, bertsolari izeneko txontxongilo bi edo hiru euren abots zalanzkorra entzunazo guran, orduan leku askotan ez baitzegoen bozgorailurik, edo zegozenak karraskada ugarikoak baitziren. Bertsolaritzari buruz neukan uste sublimea plazan lurjota geratzen jatan eta ez hainbeste neuk kantatzen nebanean, kanpoko zirkuntantziez jabetzeko baino ardura handiagoak bainerabizen neure kautan, bertso bat amaitu ezinik edo hurrengoan nondik jo asmatu ezinik. Inpresinorik mingarriena besteak kantatzen ikustean nabaritzen neban. Banenkien ez zela entzuleen errua, ez baitzegoen entzuteko obligazinorik. Baita banenkien bertsozaletasuna egizkoa eta handia zela. Eleizan be berbaro nabarmena beharko zen, nik isiltasuna eskatzeko, etsita bainengoen isiltasuna irabazi egin behar zela, ez ezarri. Bertsolaritzan ziur nengoen euskaldun asko, gehienak, bertsozale zirela, saioa une eta marko egokian aurkeztu ezkero. Ganora kontua zen. Antolakuntza falta zen. Halan, bertso saio «formalagoak» edo forma hobean aurkeztuak antola zeitekezela bururatu jatan eta halantxe eratu genduzen jaialdi batzuk, neu gai jartzaile nintzela. Kontuan euki behar da orduan, txapelketak edo sariketak kenduta, plazako saio guztiak gai librekoak zirela, nik ezagutzen neban inguruan behintzat. Euskal Herri osoan be halatsu izango zen, salbuespenen bat edo bestez harago. Salbuespenok gehienean abadeak izango ziren, bertsolariei gaiak jarten ausartzeko itzala edo ausartzia edo lotsarik eza zeukenak. Neu be abadea nintzen eta horrek emoten eustan autoritatez ez neban gatx izan ideia aurrera ataratea.

Gogoan daukat behin zelan joan ginen Abel Muniategi eta biok Azpeitiko Landetara. Aurretik hitzordua jarririk, han batu ginen, orduko Lizasoren tabernan, Jose Lizaso bera, Agirre, Lazkano eta ez dakit gehiago inor. Geure gogoeten eta asmoen barri azaldu geuntsen eta ez dakit zenbateraino bat etorri ziren, baina



edukazinoz entzun euskuen, segurrenik gure ausarkeria inozentea susmagarri irudituko jaken baina. Bueltan Elgoibartik San Migelerako aldasgoran uju galantak egin geuntsozen gauerdiko iretargi gardenari geure «Lambreta» gorriaren ganetik. Gu be gazte eta zoro baikengozen! Ez dakit zenbat, baina jaialdi batzuk egin genduzen, zineetan gehien bat. Orain Ermua, Igorre eta Lekeitio datordaz gogora, baina gehiago izango ziren. Kartela gehien bat Bizkaiko bertsolariakaz osotu neban: Balendin Enbeita, Lopategi, Azpillaga, Arregi... eta Muniategi bera, noski. Ez dot uste giputzik sartu nebanik, nire buruan honeikaz Gipuzkoan gauza bertsua egiteko asmoa baitzegoen, baina, erarik izan ez nebalako edo ideiak han onarpenik izan ez ebalako, Gipuzkoan ez zen halako ekimenik burutu.

Jaialdi harein oso gomuta ona daukat. Frankismoaren betebetean gengozen eta, antolatzeak atzera-aurrera eta oztopo (bildurra barru) ugari eragin baeban be, emoitzaz harro geratu nintzen. Gengozen errejimen politikoan egonda, ez zen bertsolaritza bakarrik jokatzen genduena. Orduan edozein euskal kultur ekimenek sistemaren begi txarra eta euskaldunen zuzpertzea zekarren. Ez dakit asmo beraren barruan ala handik euren kabuz deiturik, Usurbilgo bertso jaialdi batean gai jartzaile egin neban. Bizkaitik Lopategi eta Muniategi ziren eta besteak Xalbador, Mattin, Lazkao Txiki eta Lasarte uste dot eta ez dakit besterik bazen. Xalbador eta Mattin errezago hartu nebazen gogoan, Iparraldekoak izanik, harei beti be ezbardinago begitzen baineutsen, euren hizkeragaitik eta ondino pasatzeke nengoen eta pasatzea oso gatxa zen mugaz handiko Euskal Herriaren misterioagaitik. Saio ondoren, eleiza ondoko tabernako albopean erronda bana hartuz barriketan gengozela, Xalbadorrek gertakari eta ipuin bat edo beste kontatu ebazen eta haren kontakerak harritu ninduen. Narrazinoari indar eta ironia ikaragarria emoten eutson. Saio hareitan egin neban gaijartzeaz ez daukat gomuta handirik gaien zehaztasunean. Ziur Euskal Herriari zegokozen gaiak sartuko nebaze-

la, euskeraren inguruan batez be, besterik nekez aitatu baitzeitekeen, eta ganerako gaiak nik uste garai haretako ohikoak izango zirela, itxura hobez edo okerragoz jarriak. Orduan gai jartzea bera zan nobedade eta ez zegoen burua asko nekatu beharrik, entzuleen gogoko eta bertsolariak luzitzeko moduko gaiak asmatzen. Bolada ha laburra izan zen eta nire asmoak etenda geratu ziren, espetxea zapaltzen hasi nintzenetik. Lehenengoan bisita eta bigarrenean egotaldia.

## Pilarika egunez Markinako komentuan

Urte hareitatik oso gogoan daukadana Pilarika eguneko batzarra da, Markinako Karmeldarren komentuan egiten zena. Urte batzutan antolatzen be lagundu neban. Karmeldar fraileak, komentuko buru egiten eben batzuk behintzat, oso euskaltzale eta abertzale ziren eta euren babesa eskuzabalki emoten eutsoen bestela ia ezinezko izango zen batzar mota hareri. Ideia nondik sortu zen ez dakit, baina segurrenik fraileak eurak izango ziren eragile nagusi. Eta batibat Aita Migel Mari Juaristi, orduko priorea. Behin gogoan daukat zelan Azkoitira eroan-ekarri neban motorrean, hangoa baitzen semez. Pilarika aurreko egun batean esan eustan jaioterrira joan beharra zeukala, ez zekiela zelan, «neuk eroango zaitut, motorrean bildurtzen ez bazara» proposatu neutson eta onartu egin eban. Neuri be interesetan jatan batzar haretako kontuez berba egitea, batez be fraileak animatzeko, garai haretan edozegaitik sortzen baitziren errezeloak, baita salapenak be, baina laster ikusi neban Aita Migel Mari oso konbentziturik zebilela eta ondo asumiturik zeukala gerta zeitekeen arriskua. Gizon luzea zen eta San Migel eta Madariaga aldatsetako bihurgune itxietan kostatu jakon gure Lambretta gorriari nire sotanak eta haren habituak moldatzea. Elgoibartik gora Sallobente ganeko bihurgune zarratuan egin genduen arrastada batek abisuan ipini ginduzen:



—Jainkoaren grazian egongo gara, ezta? —hots egin neban.

—Baiezkoan nago —erantzun eban, segurrenik nigazko dudan, edo ez guztiz segur graziaren eragin terrenalean.

—Aurrera orduan! Neu be bai!

Bidaia oparoa izan zen, fraile harengan gizatasun eta abertzaletasun ezkutu handi bat aurkitu baineban. Nik artean errebelde fama neukan eta haren aurrean otzan eta arrazoizko agertu gura neban, baina bera gertatu zen nire bultzatzaile. Oso izakera eta berbakera suabearen azpian, nortasun konbentzitua aurkitu neban, Euskal Herriaren bizkunde lanean behintzat.

Markinako batzarrak famatu egin ziren bertsolaritzaren munduan. Izan ziren tirabirak, nork antolatzen eban, zer filosofia zegoen azpian, zenbaiten aldetik politizatzeko bildurra, beste batzuren aldetik batzar garrantzitsu ha zeozer gehiagorako izan zeiten gogoa. Urte batez Gabriel Arestik istilu galanta sortu eban, bertsolarien konpromezu handiagoa planteatu ebanean. Hasiak ziren bertsolariak edo oso ingurukoak atxilotuak izaten eta ez naz oso ondo gogoratzen, baina harein aldeko sinadurak edo diru eskea edo halako zeozer proposatzen eban. Batzuk ondo hartu eben, baina egunpasa lasai bat lagunartean egitera joan ziren gehienek «baztarren nahastailetzat» jo eben Aresti. Izan be, egunak berez bertsolariek lagunarteko ordu lasai batzuk alkarregaz pasatzea eban helburu, bazkal ostean bertsozaleentzat zenbait bertso kantatuz. Frankismoaren jai nagusietakoa zen Pilarika egunean, goardia zibil gorrotatuaren egunean, bazen bertsolarien artean halako berbatu bako adostasun bat, inon ez kantatzeko. Horren kontraordainez sortu zen egunari, saihets egiteaz ganera, zentzun positiboagoa emoteko burutapena. Goizean meza ondoren hitzaldi bat izango zen (urte batez behintzat neuk egin neban) eta gero bazkaria. Egun patxadatsu bat igarotera joandako bertsolariek ez eben bazkal ostean kantatzeko gogo handirik izaten, baina tartean bertsozale mordoa batzen zenez, eta bertsolariek eurek be

batzuk kantuan hasteko sakada txikia behar izaten dabenez, azkenean bertso jardun luzea gertatzen zen.

Artañola izeneko gai jartzaile bat han izaten zen, lana banatzeko desiatzen, eta, agindu ezkero, bertsolariak ez zeukan erantzuteaz beste erremediorik. Ni neu, bertsozale eta antolatzaile gisan gehiago joana, pozik egoten nintzen entzuten, baina behin Artañolak neu be harrapatu ninduen. Nire bertso bizitzako sustorik handienetakoa orduantxe hartuko neban. Beste zenbaiti kantarazo ondoren, Artañolak ez dau, ba, nire izena botaten, Lazkao Txikigaz kanta nengian? Halakorik ez neban itxaroten, nik ez baineban neure burua han kantatzen ziharduen bertsolarien mailan ikusten. Artañolak, bere kabuz edo norbaiten sujerentziaz, «apaiz bertsolari hauxe probatu behar diagu» pentsatuko eban eta nobedade polita izan zeitekeen, baina nire kolkoan zeozer zaplaka somatzen neban, untxia zakuan lez. Basarri be han zen urte haretan eta bertsolaritzaren aurrez aurre kantatu beharra larritasun ikaragarria izan zen. Atxakiren bat jarriko neban, baina niretzat be ez zegoen erremediorik. Gaia ez daukat gogoan, baina Lazkao Txikiri jarraitu neutson ahal neban lez eta, amaitutakoan, aproba itxura onean gainditu nebalakoa geratu jatan. Nire bildurra, gaur be guztiz joan ez jatana, bertsoaren erdian noraezean gelditzea zen, ez atzera ez aurrera. Hasi eta amaitu eta zeozer gehitxoago be egin neban, antza, eta gauez etxeratutakoan, abadetxeko eskaratz zaharrean, neure burua txakur uretatik urten barriak lez astintzen neban, nire izena entzuteango sustoharen ondoren, gertatua izan zeitekeen lotsaria irudimenetik egotzi guran. Zorionez, ez gertatu izanaren pozak eskuak bizkor igurtzazoten eustazen, baina gerta zeitekeelako pentsamentu aldengatxak gorputza dardaratu egiten eustan. Gero, preso nengoela, gure aita joango zen nire ordez eta harek larritasun handi barik botako eban eguna, zekien guztia kantatuz eta bere barre hezibakoa edonon zabalduz. Zenbat eta entzuleria jasoagoa, hainbat harroago ekingo eutson.

# 5. Espetxe inebitablea

## LEHENENGO ATXILOTZEA

Hirurogeta zortziko agorrilaren hamarrean, Berrizko San Lorentzo auzoan kantatzeko nintzen eta bezperan preso eroan ninduen. Aurreko urtean Durangoko eleizan Etxebarrietaren aldeko mezan egon izana zen isunaren (ehun mila pezeta uste dot) arrazoia. Egia esan, egoten saiatu nintzen, baina ez nintzen iritsi, inguruko kale guztiak poliziak harturik zeukazen-da. Beraz, hoben bako isuna izan zen, (intentzinoa zibilki be hobena ez bada), kalean erreparatu eustan txibatoren batek sartutako salapenaren ondorio. Orduan abade asko izan ginen halako edo antzeko motiboakaitik isunduak eta, gehienok ez ordaintzea erabagita genduen ezkero, ordezko hilabeteko arrestoa eragingo euskuen. Zigorra efektibotzeko eguna ez zen jakina izaten, segun noz eta nor erabagiten eben baino, eta halan denpora luze samarra igaro zeitekeen, gaur joango, bihar etorriko. Nigana une apartean etorri ziren. Amorotoko eleizan ezkontza bat egin barri zen. Eleizkizun solemnea amaiturik, ezkonbarriak eta eztailiarrak, eta halako egunetan ikusmiran batzen den herri guztia, plazan zegozen, argazkiak ataraten eta gisako eginkizun apaingarrietan. Sakristian meza jantziak erantzita, ni be banihoan, egunari zegokon trajerik barrienez (bakarra eta bera) eta abade seinaletzako altzakoiluz, eta, eleizako ate nagusiaren koska kanporatzeko urratsean bertan, gizaseme bik beso banatatik heldu eusten, «atxilo zagoz» esanez. Isilik egon balira be, harein usainean ez zegoen hutsik. Neuk atoan sinestu arren, herritarrek uste eben ezezagun batzukaz autu-mautuan nenbilela. Gauzak laster estutu ziren, danak ohartzeko moduan.

—Egizu men azkar —agintzen eusten —, eskandalurik sortzen saiatu barik.

—Ba, une aproposean etorri zarie, diskrezinoan ibili gura bazenduen.

—Lagun eiguzu autora eta han emongo dautsuguz behar diren argitasunak.

—Parka, baina hau eleizako atea da eta zuek ez daukazue eleiz eremuan eskumenik, gotzainaren baimen baga.

—Hau ez da eztabaida unea. Erdu onez, txarrez gura ez badozu.

—Nik ez dot esan ez nazenik joango. Gotzainaren baimena eskatu dot bakarrik.

—Emongo jatzu hori be, autora iritsitakoan.

—Alderantziz behar dau. Ekar baimena eta gero autora.

—Bazatoz ala ez zatoz? —besoetatik tiratuz. Artean plaza eta plaza baztarrak betetzen ebezen herritarrak ohartu ziren gure alkarrizketa ez zela parte onekoa eta berbaro alai guztia isiltasunerantz zihoan. Unea luzatzeko atxakia baino gehiago zen arrazoi bat aurkeztu neutsen:

—Aizue, ezkontza bat egin barri dot, sakramentu bat alegia, eta horrek ez dau ezertako balio, eleizako ezkontz liburuan erregistratzen ez baditut ezkonduen izenak eta behar diren xehetasunak. Lagaidazue abadetxera joaten eta sakramentuaren agiria idatzita izten.

—Hori bueltan egingo dozu. Orain geuri lagundu behar dauskuzu.

—Eleiz eremuan indarrez sartuz ganera, sakrilegio handi bat egitear zagoze, estatu konfesional baten ordezkari zarienok. Zer erru dauka sakramentuak, bere balioa arazo politiko bategaitik airean gera daiten?

Ezkontza eleiz liburuan erregistratu beharra egia zen. Abadetxea eleiza joten zegoen eta hantxe zegozen liburuak, non nik, abade lez, ezkontzaren agiria idatziko neban eta ezkonbarriek eta honein aitabitxi-amabitxiek eta lekukoek be sinatuko eben. Banenkien «sekretek» ez ebela amore emongo, baina unea luzatzeko eta hareik inondik be gura ez eben tentsinoa plazaratzeko arrazoi sendoa izan zen. Ondino ez dot ulertu zelan eleizako eta herriko ospakizun hain nabari baten aho-ahora sartu ziren, ni bakarrean harrapatzea hain erreza izanik. Herria bildurtzeko izan zeitekeela pentsatzeak ez dauka zentzun handirik, handiagoa baitzen sortarazoten eben sumina eta kontrako erreakzinoa. Indarrari kontrabide guztiak datorkoz erara, antza.



—Ikusten dozue? —hots egin neban artean isil-isilik eta zurturik zegoen plazara —. Honeik eurokaz joan behar dodala dinoe eta ez dauste ezkontza erregistretako tarterik be emon gura.

—¡No intente crear perturbaciones y hable en castellano ante nosotros!

—¡Suelten mis brazos, cuando me dirijo a mi pueblo como su autoridad religiosa!

—¡Acompáñenos inmediatamente al coche, si no quiere que le arrastremos delante de su jodido pueblo!

Azkenean joan beharra zegoen. Tatarrez eroatera behartzerainoko balientea izan banintz, eskena ikaragarria irabaziko neban, baina Amorotoko plazan egin zen pasabide luzean zehar, alde bateko eta besteko herri durditua agurtuz eta laster arte esanez, astiro-astiro joan nintzen ehun bat metrora zegoen polizi autora. Eztai bazkaria Basauriko espetxean burumakur egin neban, kanpokoak be, Lekeitioko «Hostal Emperatriz»-en, nahikoa eraginda egongo zirela pentsatuz. Bazekien eleizgizonak atxilotzen hasita zegozela, baina hain bistan eta nabarmenki euren abadea eroatea oso mingarri egin jakon Amorotoko herriari.

Atxilotuak izaten hasi barri ginen abadeok ikusmin artega samarra sortzen genduen presozainakan, zeintzuek ez zekien abade baten aurrean barruak agintzen eutsen erreberentziatik delinkuente

baten ganeko larderiara zelan pasatu. Behatxuloan lantzean begi bat besteagaz txandaka erreparatzen neban eta kaiola-piztien sentsazino irakurrietan neure burua lekutzen ez hastearren, kamainan etzun eta ez begitzea erabagi neban. Bakarrik geratzetik oso laster, atea frankuki edegi zen eta presozain batek, andaluz doinu nabarmenez, hots egin zuen:

—¡Hola! ¿Qué tal etá uté?

—TTato naonik eto uté! —erantzun neban. (Txarto nagonik eztot uste).

—¿Qué ha dicho uté?

—De momento bien. ¡Gracias!

Astebete Basaurin eginik, ganerakoa Zamoran bete neban, Irailaren zortzirarte. Abade mordoa batu ginen han, antzeko zirkunstantzietan eroanak. Gehienak isunen ez-ordainez gengozen, baina baziren epaiketan kondenatuak be, denbora luzeagorako.

## Bertsorik zirraragarriena

Bizi guztian entzun dodan bertsorik ziraragarriena Zamoran entzungo neban. Arauzko hiru egun «periodokoak» isolapen-zeldan eginik, (hantxe irakurri neban «Papillon», preso iheslariaren epopeia harrigarria), iritsi zen beste lagunakaz batzeko unea. Goizeko errelebo aldaren ondoren, hamarrak inguruan, periodoaren amai ordena heldu zenerako, lagunak han zegozen ate-sarearen bestekaldean, besoak goian, ondo etorrika. Ate bat eta beste bat krin-kran edegi-itxirik, jantoki egiten eban garaje antzeko batean nengoen. Itxura horixe hartu neutson. Besarkadak amaiturik, zortzi-hamar lagunek, aurrez aurre jarrita, bertso hauxe kantatzen dabe:



*Etorri al haiz, etorri al haiz?*
*Etorri al haiz etorri?*
*Etorri al haiz, etorri al haiz?*
*Etorri al haiz etorri?*
*Etorri al haiz, etorri al haiz?*
*Etorri al haiz etorri?*
*Etorri al haiz, etorri al haiz?*
*Etorri BAHAIZ etorri!*

Harrigarria, ezta? Noan orain bertsoa zelan entzun neban azaltzera. Niretzat, kartzelako lagunen artera sarbarri den edonorentzat lez, lehen besarkaden ondorengo unea trinkoa eta emozinotsua zen berez be. Ez dakizu zer esan, ez dakizu harrera zelan eskertu, preso zagozen lehenengo aldia izanik, atxilotze, Basauriko espetxe, kondukzino eta abar, zirkunstantzia oso barri eta mingarriek, batzutan deprimenteek, inguratu zaitue. Guztiz sentibera zagoz. Eta bat batean koru bat, unisono harrigarrian, lokalak biderkatzen dauen oihartzun inponentean, hasten jatzu: «Etorri al haiz, etorri al haiz?». Hasiera solemneagorik ez zeitekeen izan. Lurrari josita nengoen, gorputzaren dardara kontrolatu guran. Jarraitzen dau: «Etorri al haiz etorri?». Lehenengo puntu osoa galderan. Errepikaren balio adierazkorra, indargarria. Orduan ez neban hori pentsatu, baina sentitzen neban. Jarraitzen dau: «Etorri al haiz etorri al haiz, etorri al haiz etorri?». Bigarren puntu osoa be bardin-bardin. Arraro samar egiten jatzu, baina, hain hunkipen handiaren menpean, ez zara gauza barne giro haretako erreflexuak ordenatzeko. Hasierako emozinoari orain jarraipen bitxiaren espektatiba gehitu jako. Jarraitzen dau: «Etorri al haiz, etorri al haiz?». Barriro dana bardin? «Etorri al haiz etorri?». «Oh! —pentsatu neban—. Hemen txarrantxie jjaok». Jarraitzen dau: «Etorri al haiz, etorri al haiz?». Laugarren eta azken puntua bardin doala ikusirik, amorru izpi bat sortzen jatzu, lehenago konturatu ezagaitik, eta azkenean zeu be unisonoan sartzen zara: «Etorri al haiz etorri!». Sartu eta zeure

burua kakaztu, lagunen hatz erakusleak luze-luze ikusten baitozuz; kantatzen eta zuzentzen dautsuela: «Etorri BAHAIZ etorri».

—Hortxe jak, ba, koskia! Azkenian danak animatze'itxut kantatzera eta oker eitxe juek. «Al haiz / bahaiz». Azkena aldau ein bi'ok!

Etorten ziren euskaldun guztiei egiten jaken sarrera proba hori. Erdaldunen bat edo, Euskal Herrikoa izan arren, euskeraz ez zekiena bazen, esango genduen:

—«Etorri al haiz» kantauko jotsau?

—Zegaittik ez? Entzun deijjela horrek be.

Adeiz eta hunkipenez entzuten eben, balada epikoren bat zelakoan. Gero norbaitek ez eban gitxi gozatzen harrera bertsoaren esanahia azaltzen, erdaldun batzuri ulertzea kostatzen jakena bestalde.

Zamorako hil ha niretzat oasisa izan zen. Kanpoko abiada tentsoan gogoa nekatzen hasia neukan eta espetxean, lagunik handienen ondoan, hilabete amenean joan jatan, nahi beste kontu esanez, istorioak errepasatuz, planak eginez. Espetxeko errejimena hasieran ez zen hain zorrotza. Presozainek apur bat urrundik eta errespetoz begitzen euskuen, eurentzat be nobedade handia baitzen abadeak preso eukitzea, eta geure bizimodua egiten izten euskuen. Ganera noznahi zegoen baten bat zetorrena eta zihoana; gehienok isunen ordezko arrestoan baikengozen, eta, okerrenean be, aste batzuk barru barriro kanpoan dela dakiena eskegita be egon leiteke. Irailaren zortzian urten neban, hain zuzen neure herri bietarik bateko, Gizaburuagako, jai egunean. Andra Mari bigarrenean iritsi nintzen herrira eta zeharo hunkitu ninduen jakiteak, bai Gizaburuagan, bai Amorotton, ez ebela bitartean kanpoko abaderik onartu eta ez zela domeketako mezarik be izan, «geure abadie etorri arte». Honelako jarrerak beste herri batzutan be ohikoak ziren eta nabarmen agiri zen marea gorantz zetorrela. Garai hareitako konpromezuak konpentsazino handiak eskeintzen ebazen;



herri baten bizkundea geure begien aurrean azeleratzen ikusten baikenduen. Bizkunde orokorra eta batua zen ganera, ondino zatiketen eta ribalitateen desgasterik bakoa.

## «GOGOR» DISKOA

Frankismoan ez zegoen aukera ezbardinentzat tokirik, danera banantzen baitzen egur bardintsua. Irailaren hamabian, Pilarika egunean, espetxetik urten barri, nobedade handia izango nintzen Markinako Karmeldarren komentuko bertsolari egunean. Orduantxe izan zela uste dot Artañolak Lazkao Txikigaz bertsotan jarri ninduen kinka larria. Zamoran indarbarriturik eta espetxeari hortzak ikusirik, gure abade mogimentua asko azkartu zen ūdagoien haretan, batez be Derioko Seminarioko itxialdi entzutetsuan. Ia hilabetean, hirurogei bat abade entzerratuk, herrietan urrats haretara ausartu ez ziren beste askoren onespenez, eleizbarrutia eta komunikabideak airean euki genduzen. Seminarioa poliziaz inguratua zela, Gurpide gotzain txiki frankista handia orduantxe hiltea egokitu zen. Komunikabideek zinoenez, «Gurpide Monsinorea abade separatistek hil dabe». Itxialdiaren arrazoiakaz ordezkaritza bat bialdu genduen Erromara, erantzun bat jaso arte ez genduela urtengo esanez. «Eleiza pobre bat», «eleiza aske bat», «eleiza bizi bat» eta «eleiza bertoko bat» ziren gure eskarien izenburuak, gero testu luzeagoetan zehazten zirenak. Erromatik, pentsetakoa zenez, erantzuna barik gatxespena etorri zen, baina ekintza harek eleiz eta gizarte eremu guztietan astinaldi handia eragin eban. Hantxe burutuko zen GOGOR abade mogimentuaren izena, «gogorkeriaren aurka gogortasuna» lematik atarea, eta GOGOR izango zen, ekintza ha gogoratzeko grabatu genduen disko klandestinoaren izena. Orduko beste zenbait salapen kantaz ganera, diskoko bertsoak eta koplak neureak eta neuk kantatuak dira, Lopategiren «Kantatuaz» izan ezik. Ekintzaren aurkezpen gisako hirurak honeik ziren:

*Inok nahi badau gu Deriora*
*zertan gatozen aditu*
*agonian ta preso dagoen*
*Herriak bialdu gaitu.*
*Pazientzia agortu jaku*
*ta ezin gehiago sufritu*
*guk ez genduan honen nabarmen*
*inora zertan mogitu*
*Eleizak gure deiak lehenago*
*entzun nahi izan balitu.*

*Gure joko hau gerta daiteke*
*garaitza edo triskantza*
*baina badogu Eleiz jator bat*
*sortuko dan esperantza.*
*Guztion juez hor izten dogu*
*istoriaren balantza*
*gaur ez badogu bizi sentitzen*
*injustizien arantza*
*bihar geure gain bihurtuko da*
*justiziaren bengantza.*

*Zeinek ez daki gure Herrian*
*aspaldi zelan gabizan*
*goitik makila eta samatik*
*katigu txakurren gisan.*
*Gure Herri hau salbatzen gatoz*
*nahiz kondenatuak izan*
*ta politikan sartzen garanik*
*inok ez daiala esan*
*Herri honentzat behingoz leku bat*
*eskatzen dogu Eleizan.*



Gero, koruak «Egun da Santi Mamina» errepikaz lagundurik, kopla honeik kantatzen nebazen:

*Errekaldian lizarra*
*hari begira izarra*
*euskera salbo ikusi arte*
*ez dot moztuko bizarra.*

*Gau ta egun nago itxarrik*
*inun ete dan izarrik*
*Euskal Herria askatau arte*
*ez dot moztuko bizarrik.*

*Lizarrak dagoz tristerik*
*izarrak lainoz beterik*
*gaur ez daukagu bizarra mozten*
*dedikatzeko astirik.*

*Lizarrak dabez inausi*
*izarrak joan igesi*
*bizarra mozten dauanak ez dau*
*askatasunik merezi.*

*Txoriak iges nahi baina*
*kaiolan kanta samina*
*gaur ez gintzake preso egongo*
*danok bizardun bagina.*

*Begira nago begira*
*Euskal Herriro zelaira*
*lizar gazteak orriak jaurti*
*ta bizarrez jantzi dira.*

*Zuk, neska bizargabeko,*
*egizu promes betiko*
*bizarra mozten dauan gizonik*
*ez dozula inoz maiteko.*

Diskoaren alde batean «Derioko meza» lez izentatuko ziren meza zati batzuk zetozen. Lekuonaren «Hiltzaile bat bezela» eta «Eliza pobrea» kantuez ganera, bertso bi honeik kantatzen nebazen Eskaintzan:

*Aita Jainkoa, danon izenez*
*Zugana nator kantuka*
*Zuk ontzat hartu dagizun gure*
*une hontako burruka.*
*Guk Herri hauxe salba nahi dogu*
*nahiz mundua jaiki aurka*
*baina hortako Zugandik behar*
*dogun laguntza ez uka.*

*Etxe honetan zergaitik sartu*
*garan Zuk ondo dakizu*
*etsaiak emon nahi ez dabena*
*Zuk, otoi, lortu eiguzu.*
*Gure Herria lurrak irusten*
*Jainko Jaun, izten badozu*
*nok sinestuko dausku Herrien*
*Salbatzaile zarala Zu?*



*Eta Jaunartze ondoren beste biok:*
*Oh, Jesukristo, asmo bakar bat*
*lur hontan izan zenduan*
*alkar maitasun hitza eskeini*
*zeuskun azken aginduan.*
*Hona hemen gu danok baturik*
*zure maiaren onduan*
*Gure Herria salbatu daiten*
*zure nahia dan moduan.*

*Israeleko herri txikian*
*jaio, hazi ta hil zinan Zu*
*zure odoleko hareik gaur euren*
*lurraren jabe dituzu.*
*Euskal Herriak Zugan sinestu*
*dagiala nahi badozu*
*zure herritarrak egin dabena*
*lortutzen lagu eiguzu.*

Urte hareitan Israelek ez zeukan, euskaldunon artean behintzat, geroago irabazi dauen ospe zitalik. Ondino estatu barri gaztea zen eta Israelen lorpena Euskal Herriarentzat biziki desiragarri joten genduen. Horrez ganera, Bibliako Israeli Eleizak murrizki eta susmagarriro emon dautson esangura erlijiosoan eduki politikoa be erantsi gura genduen. Bertso honeitan «salbatu», «salbatzen gatoz», «salba nahi dogu» eta honelako esapideek hantusteegi emon daikie gaur, baina kontuan euki behar da hizkera erlijiosoan eta liturgikoan «salbatze, salbamen, salbatzaile» kontzeptu zentralak direla. Diskoa grabatzea Derioko itxialdia amaitu eta gero bururatu jakun.

—Zergaitik ez dogu disko bat grabetan, Derioko itxialdiaren eta GOGOR mogimentuaren lekuko izan daiten?

Jose Antonio Retolaza izan zela uste dot ideiaren ekarle. Ideia sinplea zen. Itxialdiko meza bat balitz lez aurkeztuko genduen, Derion kantatzen genduzen eta ekintzaren izpirituagaz bat zetozen kanta batzuk sarturik. Egun batez, itxita egon gineneta-riko hogei bat abade, kantatzeko trebetasun gehien zeukenak, batu ginen eta, entseiu bat eginik, danak erreskan bota genduzen. Gero grabazinoa ordenatu eta behar ziren lanak eginik, —Jose Antonio Retolazak egin eban lan gehiena —, Iparraldera eroan zen, han non-bait editatzeko. Halakoxe bidaia batean ezagutu neban Telesforo Monzon, zeinari ideia asko gustatu jakon. Orduan gertaerak arin pilatzen ziren eta hirurogeta bederatziko maiatzaren hogeta hama-rrean bost abadek gose greba bat hasi genduen Bilboko Gotzain-degian eta hortik etorri jakun espetxealdi luzea.

## ZAMORAKO ESPETXEALDIA

Deriokoek grabatutako diskoa ezagutzeko aukerarik ez genduen izan. Halako batean, Zamoran preso denboratxoa generoala, hor jakinazoten dauskue gure zorioneko diskoa, ia atarateko zenik be ahazturik genduena, argitaratua zela eta eskurik esku zebilela klan-destinoki. Ikaragarrizko poza hartu neban. Zinta ha grabatzean, lehenengo aldiz sentitu neban bertsolaritza eginkizun handitzat; edo, hobeto esateko, lehenengo aldiz sentitu neban neure burua bertsolaritzaren eginkizun handiaren barruko. Artean egindako pla-zetan, abade-bertsolari binomioaren bitxitasuna eta indar posiblea somatua neban, baina ez neukan bertsolaritzan inora heltzeko ames kontzienterik. Nahizta harra eta zaletasuna euki, ez zen nire anbi-zinoen zerrendan sartzen. Derioko diskoan, ostera, bertsolari lez be nonor nintzela edo izan neintekeela nabari neban, hain lan garran-tzitsu eta arrakastatsu bateko protagonista bihurtu bainintzen. Izan be, GOGOR diskoa oso entzuna izan zen euskal sendi eta talde ekintzaile askotan. Kristinau askorentzat haxe bihurtu zen meza alternatibo. Eleizara joan beharrean, GOGOR entzunez betetzen eben domeketako eginkizuna. Polizien erregistroetan edonoz itaun-duko eben ea «abade separatisten» diskoa non zeuken eta, aurki-tzen baeben, amorruz eroango eben. Honelako barriak iristen jaku-zen Zamorara eta esan beharrik ez dago poz handiz hartzen gen-duzela. Niri, pozaz ganera eta neure isilean, sentipen bikotxa gara-tzen jatan kolkoan, poza baino bortitzagoa beharbada. Batetik harro-tasunari lasai korritzen izten neutson, espetxearen gogortasunari eusteko balio eban heinean. Denpora pasatzea ez litzateke bape arazo, pentsamena zerbaitegaz ibilarazo behar ez balitz, eta pen-tsamena hain bizkorra izanik, pentsakizun asko behar dozu, eguna betetzeko. Gauean loezinak joten bazaitu, barriz, edarra datortzu. Orduan neure abotsaren entzule jarten nintzen, ezagutzen ninduen etxeetan eta herrietan, eta ondoko entzuleen esklamazino gores-garri eta karinozkoak imajinatzen nebazen eta ezagutzen ez nin-duen Euskal Herriko etxeetan itaunak entzuten nebazen:

—Norena dok ahots hori? Nor dok bertsolari hori?

Izan be, diskoan ez zen ezein egileren izenik ez ezelako datu pertsonalik agiri eta ezagutzen ez ninduenentzat abots intri-gantea zen ha.

—Nor dok hemen kantetan deuen bertsolarie?
—Xabier Amuriza.
—Nor dok hori?
—Gizaburuagako eta Amorotoko abadea.
—Non yagozak herri horreik?
—Bizkaiko kostaldean, Lekeitiotik hur.
—Eta bera nongoa dok?
—Bizkaikoa izan behar yok.
—Bizkaiko nongoa?
—Etxanokoa, antza. Zornotza-Etxanokoa.
—Zer dok hori?
—Amorebieta esan yakona. Amorebieta-Etxano.

—Eta orain non bizi dok?
—Non bizi nor?
—GOGOR-eko bertsolari hori.
—Oh! Preso yagokela uste yoat, Zamoran-edo.

Honelakoxe pentsakizunetan gozatzen nebazen egunaren eta astearen ordu askotariko batzuk eta ez zen, ez, pentsaketa funtzionala edo denpora pasagarri soila. Sinestu be egiten neban zeozer banintzela, harrotu be egiten nintzen, ez baitzen guzurra diskoa euskaldun askoren bihotza hunkitzen ari zela. Gure etxean bazen tokadisko gorri txiki bat, diskoaren azpian guztiz ezkutatzen zena, eta gure aitak aparatua hartu eta auzo guztietan entzunazoko eban. Horrek danorrek hanpatzen eta apur bat lotsatzen banindduen be, txakurrarena egin jatan hunkigarrien. GOGOR diskoan nire ahotsa entzunaz batera, etxeko txakurra zoraturik paretan ei zen, ahotsaren jabearen bila. Eskaratzean aurkitzen ez ninduelarik, etxeari itzulika ekingo eutson, ahausi minberaz eta dei uluka. Gure aitak etxe ingurura arrimatzen zen edonoren aurrean barrituko eban txakur penatuaren ikuskizuna.

Sentipen harrotzaile honen iruntzian bazen erantzukizunezko zama bat. Orain ez neukan ez nintzela edo ez neintekeela izan esaterik, nire ahotsa Euskal Herri osoan baitzebilen. Batzutan, patioan atzera-aurrera, belaunetan somatzen neban dardara ez nenkien bertigoarena eta bildurrarena ez ete zen. Dardara jauzi batzuk eginda joango zen, baina sentipen menperatzailea bertan geratzen zen, honako pentsamentuz jareiten nebana:

—Zati baten libre hao bahazen-ez hazen dudeko konpromisoetatik. Hemendik urten orduko, iñok gogoratuko ete jjok ezer? Da orduen hik zapla emongo'tsiek danari, bittartien preparetako astijje eukik'ok-eta. Oi, espetxe zantar! Zozer onik bi'euan hik be!

Pentsaketa honeik guztiok lehenengo urtekoak ziren, espetxearen azkenik begiztatzen ez genduen sasoikoak. Alde horretatik kanpoko karga imajinario guztiak hartzeko moduan nengoen, larrienak baziren be. Bestetik zer gurago karga horrein aukera lehenbailehen hel zeiten baino? Preso dagoenak askatasunari ez dautso pisurik ikusten. Bai, ostera, behar dau katigutza zegaz bete, zenbat hutsago, hainbat astunago baita, eta nik, bertsolaritzaz egitea pentsatua neukan lanez ganera, benetako bertsolari izatea pentsatzeko be banebala sobera denpora bururatzen hasi jatan, bide batez espetxealdia eroateko ames polit bat izan zeitekeelarik. Abade-bertsolari binomioaren emoitza, abadetzan jarraitzeko probabilitateak gitxitzen ikusi ahala, bertsolariaren aldera makurtuz zihoan. Eta zoritxarrez, edozetara mentalizatzeko astia eukiko neban.

Zamoran gagoz urte mordo baterako. Bilboko Gotzaindegiko gose greba baten ondoren, (hiru egunen buruan atxilotu ginduezen, eleizaren aldetik baimen konkordatario guztiak asko kosta barik lortutakoan), astebete barru Burgosko auzitegi militarrean epaituak eta kondenatuak ginen. Inoz armarik eskuetan ikusi barik, ez dakit zein mailatako «subertsinoa» egotzi euskuen. Nire aurreneko lana, Basauriko espetxean hasia eta gero Zamoran burutua, gure ekintzaren eta bere ondorioen barri bertsotan emotea izan zen.



## Euskal Herritik aparte

1)

*Euskal Herritik aparte*
*mila legoa bitarte*
*esku ta hanka loturik preso*
*Zamoran naukate.*
*Pentsaturik zenbat urte*
*behar dogun hemen bete*
*pazientzia hartu beharko*
*libre itxi arte.*

2)

*Nahizta kriminal ez izan*
*kaiola txorien gisan*
*bost gizon handi kolpera preso*
*sartu ginduezan.*
*Baina zegaitik izan zan*
*nahi neuke poliki esan*
*inozentzian bizi diranak*
*itxartu daitezan.*

3)

*Maiatzeko egun batez*
*hogetamar hain suertez*
*gose greba bat hasi genduan*
*geure borondatez.*
*Goitik laguntzarik bapez*
*guztia zan geure kaltez*
*obispo ta apaiz kolko handiak*
*lasai bizi beitez.*

4)

*Pentsatutako moduan*
*Bilboko Obispaduan*
*sotanu baten gela zahartxo bat*
*atondu genduan.*
*Poliziak inguruan*
*jarri jakuzan behinguan*
*gure sabelak etzun goserik*
*sentitzen orduan.*



5)

*Paper bat geunkan egina*
*laburra baina gordina*
*bertan azaltzen genduan Euskal*
*Herriko samina.*
*Zer sermoi ta zer dotrina!*
*Bazan zerbaiten premina*
*barriro ere egingo geunke*
*kanpoan bagina.*

6)

*Hiru egun ta erdira*
*lotu ta komisarira*
*ardi gaxoen antzera goaz*
*geure hiltegira.*
*Jotzen hasiko balira*
*bizkarrik ez erretira*
*lehenago ere emondakoak*
*danak hartu dira.*

7)

*Geroztik astebetera*
*tribunal faltso batera*
*azaldu ginan geure krimenen*
*kontu emotera.*
*Mila arrazoi atera*
*ebezan gure kaltera*
*karga ederra debalde jaso*
*genduan kolpera.*

8)

*Tribunaleko nausia*
*trumoi artetik jausia*
*gizona ala piztia zer zan*
*dudan gagoz ia.*
*Eztula ta aharrausia*
*haren zientzi guzia*
*esku onetan dago, mutilak*
*gure justizia.*

9)

*Ezker eta eskubira*
*ha zan ezpata dizdira*
*pentsa zeiteken sartu ginala*
*subeen habira.*
*Ikaraz nengon begira*
*bost juezen aurpegira*
*akerrak ere haien ondoan*
*pizti finak dira.*

10)

*Juizio zelebre hatan*
*poz bat neban neure baitan*
*halako pizti saila debalde*
*ikustea bertan.*
*Baina gauza baten faltan*
*geratu nintzan penatan*
*buztanik euken begiratzea*
*ahaztu egin jatan.*



11)

*Autortu nahi dot hortako*
*abogaduak ainako*
*saio bikainik San Pedrok ere*
*ez eban botako.*
*Baina guztia zetako*
*alperrik hitz baterako*
*berbetan jardun nahiz zaunka egin*
*bardin zan harako.*

12)

*España bat, handia ta*
*librea zelan ez kanta*
*Gibraltar izan ezean hemen*
*ez da ezer falta.*
*Askatasunez aparta*
*handian barriz galanta*
*Holako España bat izan behar*
*besterik ez da-ta.*

13)

*Agur eginik Burgosi*
*nahizta ez asko merezi*
*bueltan gentozen Criado jauna*
*gendula nagusi.*
*Bakotxak zazpi polizi*
*euren pistola ta guzi*
*bideak libre ziran igesi*
*nahi bagendun hasi.*

14)

*Heldu ginan Zamorara*
*inpernu zulo hontara*
*Jainkorik bada dagon lekutik*
*gaizala anpara.*
*Urte batzuren bolada*
*gu hemen izango gara*
*bien bitarte Euskal Herria*
*askatzen ez bada.*

15)

*Pilatos eta Herodes*
*izan da gure juez*
*Ana ta Kaifas ere gustora*
*geratu daitekez.*
*Hala ere gure partez*
*lasai gagoz eta bakez*
*askatasuna kendu dauskue*
*baina umorerik ez.*

16)

*Horra amaitu baino lehen*
*bost gizonok nortzuk ginen*
*bat da Gabika hurren Kaltzada*
*Naberan ondoren.*
*Amuriza da laugarren*
*nor falta ete da hemen*
*guztion buru Nikola jarri*
*behar neban goren.*

Nikola Telleria, Sopelako parrokoa, nahikoa adinekoa zen, ekintza haretara batu zenean. Sei urte preso eginda, erdi hilda etxeratu zen espetxetik eta ia askatasunik ezagutu barik zendu zen 1975ean, 59 urte ebazela. Nabarnizko hilerrian ehortzita dago. Besteok hor gabiz ondino abian. Hamairugarren bertsoan agertzen den «Criado jauna» orduko Bilboko komisario sekretu ospetsua zen, zuria baizen zitala. Zuria ez azalez, orbela baino igarragoa baitzen, batez be betaurreko baltzak jazten ebazenean. Zamoran bertso honeik lagun artean kantatzea dibertsino urrietako bat zen eta, denpora sobra zegoenez eta gogoa ondino fresko, espetxeko bizimodua be bertsotan jartea pentsatu neban.



## BERTSO BARRIAK, HORMA ZAHARROI JARRIAK

1)

*Bertso barri batzuek*
*behar ditut jarri*
*entzumenik daukenen*
*entretenigarri.*
*Katez loturik preso*
*gaitue ekarri*
*kantuz azalduko dot*
*espetxeko barri*
*inuzentzian inor*
*ez daiten etorri.*

2)

*Espainian behera*
*han dago Zamora*
*basamortu hobarik*
*nunbait izango da.*
*Ez mendi ez itsaso*
*ez bedar ez lora*
*hementxe bizi behar*
*hainbeste denpora*
*hain maite dogun Euskal*
*Herritik kanpora.*

3)

*Etxetzar bat hemen da*
*itxuraz bikaina*
*goralduko neukena*
*gorroto dot baina.*
*Erdia zementu ta*
*erdia burdina*
*gizonak piztitzeko*
*apropos egina*
*hoba zan inpernura*
*erori bagina.*



4)

*Ilunpe hontan bizi*
*gara erdi hilak*
*ondo itxita dagoz*
*ate ta zerrailak.*
*Inguruan polizi*
*ta goardi zibilak*
*batzuk pistolak eta*
*besteak fusilak*
*galtzeko arriskurik*
*ez dago, mutilak.*

5)

*Kanpotik inpernua*
*dirudin kaiola*
*barrutik txarritoki*
*edo zerbait hola.*
*Jaten behintzat lujorik*
*ez dogu inola*
*tantaka zurrupatzen*
*dauskue odola*
*oraindik bizi gara*
*nik ez dakit nola.*

6)

*Kartzelan sartu eta*
*lehenengo kolpian*
*zer ikusteko nintzan*
*asko ez nenkian.*
*Zerbait gordeta edo*
*neukan atxakian*
*eskua sartu eusten*
*gantzontzilopian*
*sekula inork ikutu*
*ez daustan tokian.*

7)

*Goizean goiz ohetik*
*jagi egunero*
*ur salda zikin batez*
*gosaria gero.*
*Eguerdian baba baltz*
*ta holako jenero*
*hemengo potajeak*
*probatu ezkero*
*bizkarrak gizentzerik*
*ez dogu espero.*



8)

*Baba baltzak nasturik*
*harri eta arrez*
*hemen gabiz haginak*
*iruntsi beharrez.*
*Sabela putzez bete*
*besterik ezebez*
*gainera gerrikorik*
*ibiltzen itxi ez*
*prakai soinean eusten*
*ez daukagu errez.*

9)

*Sabela hutsik eta*
*loturik mingaina*
*goitik behera zigorra*
*txakurrak baigina.*
*Hau da gertatu jakun*
*espetxe zikina*
*oraindino burutik*
*sano gagoz baina*
*badira motiboak*
*zoratzeko aina.*

**10)**

*Nagusi bat daukagu*
*zirkuan hazita*
*pizti bildurgarria*
*aurrez ikusita.*
*Oraindino berbetan*
*ez dau ikasi-ta*
*uhuka hasten jaku*
*begiak itxita*
*orangutan garbia*
*trajea jantzita.*

**11)**

*Lotsagarri da baina*
*sinestu hau, jaunak*
*ate barik daukaguz*
*hemengo komunak.*
*Testigu barrik hortan*
*ohituta ginanak*
*agirian ein behar*
*ezkutuko lanak*
*erakutsi ditugu*
*dokumentu danak.*



**12)**

*Deskuidoz inork ezer*
*egitera oker*
*kalabozo batean*
*sartzen dabe laster.*
*Hantxe hainbeste aste*
*nahizta barruak leher*
*ez ohe ta ez aulki*
*ez mahai ta ez ezer*
*arratoiak hobeto*
*dagoz mila bider.*

**13)**

*Nahizta mila gizonek*
*izan gure kargu*
*Madrilera jo behar*
*ezer nahi badogu.*
*Handik, barriz, ezetza*
*aurretik dakigu*
*gorroto gaitue ta*
*zetako erregu*
*holakoxe piztien*
*eskuan gagoz gu.*

**14)**

*Obispoak gurekin*
*ondo egon nahiez*
*noizbehin etortzen jakuz*
*baina gu joan ez.*
*Ia nazka gaitue*
*hainbeste folklorez*
*hoba hurrengo Apolon*
*astronauten ordez*
*betiko itargira*
*botako balebez.*

**15)**

*Konkordatu zikin bat*
*hartuta atxakitzat*
*militarren eskuan*
*Eleizaren giltzak.*
*Obispo jaunok horri*
*eusten gauza handitzat*
*gaiztoak ez badira*
*tentelak bai behintzat*
*edo biak batera*
*hobeto deritzat.*



**16)**

*Bisita egunak ere*
*begira zer dian*
*amagaz egin behar*
*erdera garbian.*
*Ganera burdinazko*
*sare bi erdian*
*eta alkahuete bat*
*albotik goardian*
*burduntzia sartuko*
*neuskio ipurdian.*

**17)**

*Ilunpean dagonak*
*maite dau argia*
*baita egarri danak*
*ere ur garbia.*
*Noizbait hausiko ahal da*
*gure buztarria*
*hazia sortzen denez*
*lurpean jarria*
*kartzelan erneko da*
*Euskadi barria.*

Bertso honeik, aurrekoak lez, bizkaieraz egin nebazen, gero «Menditik Mundura» liburuan batura egokiturik argitaratu baziren be. Geroztik, jente aurrean kantatu izan dodazenean be, bertsino egokituan emon dodaz, baina uste dot horretan oker egin nebala edo gitxienez ez neukala bertsino orijinala, orduan niretzat ohikoa zena, ezetara egokitu beharrik. Epaiketaren eta espetxeko bizimoduaren bertso honeik sarri kantatzen genduzen Zamoran. Horrez ganera, halako bertso eskola bat be abiarazo genduen, entretenigarri moduan gehienbat. Bazkal ostean sei-zortzi lagune-

ko talde bat mahaian geratzen ginen, bertsotan eginez. Batzuk gehiago, beste batzuk gitxiago, danek egiten eben zeozer eta gitxien egingo ebanak be behintzat entzule bat eta eritxi bat aportatzen eban. Lehenengo urtean ondino oso fresko gengozen eta bazkaloste gozatsuak osotzen genduzen, baita nekosoak be, bertsotan egitea buruhauste handia baitzen guretzat. Modurik gehien euki arren, neuri be asko kostatzen jatan kantatzea, eguneroko mahai beraren eta lagun beren inguruan. Lagunek batzutan esaten eusten bertso biribilegiak botaten saiatzen nintzela eta ez eukitzeko bildurrik, txarrik inon botatzekotan, espetxeak merezi ebala-ta. Barrurago ez ginduezen sartuko. Halan be, asko kostatzen jatan. Lagun batzuk polito aurreratzen ebela ikusirik, nahiko luzaro eutsi geuntson bazkaloste hareri. Oso saio informala zen, ezelako ordena bakoa, bakotxak ahal ebana ahal ebanari kantatuz. Inoz gaiak jarrita be egingo genduen, baina bazkalostea ez zen diziplinan sartzeko une aproposa. Ez dakit zenbat denporan eutsiko geuntson, baina bigarren urterako ohitura ha amaitua zen. Ez dot uste nekeagatik izan zenik. Espetxean nekea ez da arrazoi, denporari eusten bardin jarraitu behar baita. Ez neuke esango umorea galdu genduenik, espetxean horrek be ez baitau ezer konpontzen. Ez badago, etara egin behar da. Beharbada bigarren urterako umorea aldatu egin jakun. Gogoan dot lehenengo urteko bazkaloste hareitan sarritan komentatzen genduela:

—Urtebete hemen igarotakoan, eukiko ete jjuk zertaz berba ein?

Bigarren urtean aurrera ginoazela, esango genduen:

—Urtíenak antxiñe ein jjok eta ondiño berbetan jarraitzen jjuk.

Egia da. Berbakizuna ez da inoz amaitzen. Beti dago zeri ekina eta zer pentsatua, bizirik zagozen bitartean. Baina bertsotan ekiteko, guk egiten genduen moduan behintzat, inguru freskoagoa eta bariatuagoa behar dela dirudi. Ez genduen neke haretan gozatzen, egunerokotasun beti bardinean zirkunstantziak ahitu ziren, kanpotik ekarritako erreferentzia freskoak zimelduz joan ziren, bertso jardunak eskatzen dauen markoa ezarian-ezarian ezabatu egin zen eta berez-berez amaitu zen, amatatu zen, gure bertso eskola. Gero, denpora luzatu ahala, bizimodua konplikatu egiten da, espetxeko errejimenagazko gatazkak eta tentsinoak sortzen dira eta beste kanpo eta barne egoera bat abiatzen da. Gure lagunarteko bertsogintza behintzat lehenengo urtean agortu zen. Urte batzuk igarotakoan, inoz esaten genduen:

—Len bertsotan be eitten genduan, ba! Zegaittik ezkozak barriro saiatzen?

Ez genduen, antza, motibazinorik aurkitzen edo ez dakit zegaitik zehazki, behintzat gehiago ez ginen sekula hasi. Ez dot uste espetxea bat bateko bertsogintzarako bape leku emonkorra denik. Niretzat ez zen izan behintzat. Urteak joan ahala, espetxeko bizitzaren barne sentiera zelan aldatzen den antz bat beste bertso sorta batek emon daike, laugarren urtera jarri nebana bera. Honeik orijinalean be euskera batuan dagoz.



## Bertso berriagoak, horma zaharragoei jarriak

1)

*Otsoak zazpi ume*
*atsoak hiru haur*
*preso sartu nautela*
*lau urte dira gaur.*
*Egunak luze bezain*
*esperantzak labur*
*Askatasun Amari*
*gure partez agur.*

2)

*Senarra izorrante*
*emaztea izor*
*bizirik ehorzteko*
*ez zen jaio inor.*
*Hormadi zatar hori*
*jarri zutenei hor*
*gorrotoa besterik*
*ez diet ezer zor.*

3)

*Gure mando gaxoa*
*eztulka zen ito*
*kartzelan berdin zaigu*
*deabru nahiz jainko.*
*Burua hormaren kontra*
*jaurti eta kito*
*ea bietatik bat*
*hausten den betiko.*

4)

*Sitsak hiru fraileri*
*zilborra jan zien*
*aurreko etsipen hitzak*
*gezur hutsak ziren.*
*Zer horma, zer kartzela*
*ez naiz penaz hilen*
*gaur maite dut bizitza*
*sekulako gehien.*



5)

*Bi zorrik egin zuten*
*zerri lapurreta*
*ez pentsa nagoela*
*gibelak erreta.*
*Noizbait helduko ahal da*
*itsasora erreka*
*kartzela serioan*
*hartzen dut barreka.*

6)

*Ahuntzak bizarrak bere*
*haitza izerbera*
*eguna pasatzen dut*
*berdetik berdera.*
*Nahastu zait euskera*
*ahaztu erdera*
*nahaspilduko nuke*
*Luzifer berbera.*

7)

*Oilarra oilo zale*
*uda eta negu*
*lau hormei pix juxtuan*
*egiten diegu.*
*Lumak harrotu eta*
*arraultzak zimeldu*
*lasai libre uzteko*
*moduan gaude gu.*

8)

*Trenibe bat egin dut*
*bere bi errailak*
*direna kartzelero*
*jaunen barrabilak.*
*Bertan gora ta behera*
*tren bat darabilat*
*dibertsio hoberik*
*ez dago, mutilak.*

9)

*Arraultzek brist eta brast*
*gorringotzen elkar*
*gurpilak irristaka*
*trena iraultzear.*
*Madril ere nuela*
*tortilatu behar*
*tatarrez itzartu naiz*
*ohapean zehar.*

10)

*Ez dela badelako*
*mundua komiko*
*amets hau egi balitz*
*geundeke polito.*
*Birrintzearren hoien*
*aleak betiko*
*neure bat pozik nuke*
*trenpera jaurtiko.*



11)

*Ohean asperturik*
*komunera alde*
*gure gau-klub bitxia*
*gainera debalde.*
*Nahizta emakumetan*
*aukera handi gabe*
*galtzak kentzeko behintzat*
*badut libertade.*

12)

*Pizontziei banaka*
*apuntatzen diet*
*nahizta tentatzen nauten*
*makurtegi biek.*
*Eskolan edukirik*
*komenentzi hauek*
*ez nituen pasako*
*estualdi haiek.*

13)

*Bizitza Jainkoaren*
*dohain bikain omen*
*kaka kolore eta*
*usaina du hemen.*
*Jakintsuak galdezka*
*gizona zer nor den*
*komuneko zulotik*
*ikusten da ondoen.*

14)

*Noizbait filosofoei*
*sinestu niena*
*okadaka botatzen*
*ari zait barrena.*
*Bonbari tiraturik*
*hau duk gozamena*
*nola urak daraman*
*kakatara dena.*

15)

*Norinahi diot barre*
*egingo to zein no*
*ahotik ezin bada*
*ipurditik koino.*
*Heltzen bazaizkit zulo*
*hau ere ixteraino*
*ez duket barrez erre-*
*mentatzea baino.*

16)

*Galtzak jaitsi baino ez*
*altura erdira*
*horra bi kartzelero*
*leihotik begira.*
*Baldin mamu berdeok*
*gizonak badira*
*nire uzkiak dauka*
*ispilu dirdira.*



17)

*Nola biak baitira*
*marikoi famatu*
*neuk seinalatzen diet*
*nora begiratu.*
*Hau izorrategia*
*dutena muntatu*
*atzetik eman eta*
*gainera kobratu.*

18)

*Galtzak ditut burdina*
*sarean eskegi*
*barreak urtzen dizkit*
*sudur eta begi.*
*Desbarrabilmendu hau*
*ez al da gehiegi*
*gau on marikoi jaunak*
*osasuntsu segi.*

19)

*Leiho zulotik galdez*
*nago bi izarri*
*ez nagoen uste*
*bezain barregari.*
*Bihotza dadukanak*
*triste edo larri*
*eman mun buztanpean*
*aker zaharrari.*

Bertso sorta hau egin nebanean, ez jatan burutik pasatu aurreko sortaren ezbardinak egiterik. Hareik lez, honeik be unean uneko bulkoaren arabera urten eben. Honeik batuan eta beharba-

da estiloan ahozkotasun ohikotik urrunago, baina besterik ezebez. Espetxetik urten eta oso gero, MENDITIK MUNDURA liburuan argitaratzeko berrikusi nebazenean, orduan ohartu nintzen sorta biak oso diferenteak zirela. Batean urtebete besterik ez neroan preso eta bestean lau. Sorta honetako umorea korrosiboagoa da, eta estiloan be, —errima, irudiak, esaldien ordena eta abar—, ohiko ahozkotasuna eskrupulu barik bortxatzen da, komeni denean. Bertso honeitaz ganera, nozbehinka beste batzuk jarri nebazen, batzuk MENDITIK MUNDURA liburuan argitaratuak eta beste batzuk galduak. Sorta batzuk gertakarizkoak jarriko nebazen —Burgosko epaiketa, motina eta espetxeari su emotea, gose grebak eta holakoak —, eta beste batzuk tematikoak edo gai bati buruzkoak — «Apaizak eta neskazaharrak», «Izugarri bat», «Anbotorekin trukean», «Ez naun mainontzi», «Gasolina madarikatua» eta abar —, baina guztira be ez asko. Dozena bat sorta edo dozena eta erdi goia? Hainbeste urtetan izateko, oso gitxi da hori.

Lehenengo urtean, «Euskal Herritik aparte» izeneko epaiketari buruzkoak eta espetxeko bizimoduari buruzko lehenengo sorta, beharbada beste zerbaitegaz batera, kanpora bialdu nebazen, libre zihoan bategaz. Izan be, espetxean egiten denak ez dauka ezelako interesik, kanpoan ezagutuazoteko ez bada. Lehenengotan errezagoa zen gauzak etaratea, baina gero egoera asko estutu zen eta urte batzuk egin genduzen, inor sartu ez urten barik, eta ezinezkoa zen ezelako paperik kanporatzea. Ahal zenean be, aukera bakarra nonor kaleratzea zen eta orduan ahalik «kargarik» txikiena komeni zen, arrisku barik pasatzeko, eta horretarako bazen nire bertsoak baino aurreragoko mezurik. Beharbada horrexegaitik ez neban bertso gehiago jarri. Egia da jar neikeela, azkenean neuk buruz etarateko bazen be, (eta batzuk halantxe kanporatu ziren), baina azkena urrunegi ikusten neban, ezetara motibatzeko. Gure kanpoagazko harremon zirrituak oso murritzak ziren eta aukera izpiren bat sortzen zenean, bazen hamaika arazo garrantzitsuago, bertsoen kapritxoan zirrituak okupatzeko baino. Ganera nora edo nori bialdu? Gure harremon-sare posible eta orokorraren arduretan, norbanako baten bertsoak milagarren garrantzian kontsidera zeitekezen eta bertsoa lako sorkuntza hain pertsonala eta norberetzat intentsoa harrera indiferente batera bialtzerik ez dau inork maite. Honeik edo antzekoak izan daitekez nire espetxeko produkzino urria espliketan daben motiboak.

Lehenengo urtean aisa lortu neban aitatu bertsoak kaleratzea eta nozbehinka iristen jatazen barriak, zelan urliak edo zelan hain lekutan «Euskal Herritik aparte» eta Zamorako bizitzari buruzko bertsoak kantatzen ziren. GOGOR diskoagaz batera, bertso honeik arrakasta izan ebela jakiteak neure bertsolaritasun posiblean indartu egin ninduen eta pentsatzen hasi nintzen, nonoz espetxetik libratutakoan, benetako bertsolari izan neintekeela, ez erdi amateurra, aurreko abadetzan lez. Neure burua bertsolari imajinatzeak poztu eta erakarri egiten ninduen eta pentsamentu hori, espetxeko ordu luzeetan, distrakzino atsegina neban, astiro-astiro irudipen entretenigarria besterik ez zena erabagi anbizinotsu bat bilakatuz. Bertso askorik jarri ez neban arren eta gure lehen urteko bertso eskola bertan behera amaitu zen arren, nire buruak ordu asko alperrik galtzen eban bertsoen inguruan eta, halan be, ezin neban nahi beste galdu, espetxean denpora geldia beti baita badoana baino luzeagoa.

## Hiztegi errimatua espetxean

Bat-bateko bertsogintzari ekiteko, espetxea leku petrala izan arren, (nire kasuan behintzat), ikasteko eta zenbait ikerlan egiteko balio dau. Horixe da presoen denpora amaibakoa bete samartu daikeen aukera bakanetako bat, tailerretarako eta eskulanetarako erarik emoten ez badautsue. Guretzat bide hori itxita zegoen, beste presoakaz, komunakaz, edozelako harremon oro moztua baikenduen. Preso langileren bat, igeltsero edo halako huskerigile bat, gure pabi-

lioira zeozer konpontzera ekarten ebenean, barregarriro entzerratzen ginduezen, inork ikus ez gengizen, hondakin radioaktiboak baikinan. Egin geinkeen kirol edo patio korritzez ganera, irakurtea eta ikastea zen aukera bakarra, berau nahiko ahalbide urriz eta nekosoz, bai gaien aldetik, frankismoari begiko ez jakon guztia zentsuratzen baitzen, bai euskeraren aldetik. Euskal liburuek, espetxeko sarrera atetik gure eskuetara, bidaia luzea egiten eben, sarritan Madrildik bueltan, bidean lizuntzeko beste denpora eginez, jakinik gerotxoago be han egongo ginela.

Bertsolaritzaz espetxean egin neban lanik garrantzitsuena, luzeena behintzat, hiztegi errimatua izan zen. Aurretik baneban ideia orokor bat, edo susmo bat areago, errimaren ahalbidetik oso zati txikia baliatzen ete zen, baina halako lan bat kanpoko atzera-aurreran ez zegoen egiterik, denpora luzea eta jarraitua behar baiteban. Oraingo bitarteko informatikoekin be lan handia litzatekeena, pentsa hiztegiko berbak banan-banan begiratzen, eskuz idazten eta gero sailetan ordenatzen eta berridazten zenbat denpora beharko zen. Zorionez, espetxean denporak ez ginduzen ikaratzen ezagatik, soberagatik baino, eta zenbat eta zeregin luzeagoak hartu, hainbat hoba egilearentzat. Halan, Azkueren hiztegia hartu neban lan oinarritzat, orduan eskura neukan eta ezagutzen neban hiztegirik osoena. Lehenengo lana Azkue atzekoz aurrera jartea izan zen. Berba guztiak banan-banan transkribatu behar ziren, azken silabaren arabera moltzo handietan sailkatuz. Esaterako, LA amaieradun guztiak moltzo batean, OR amaieradunak beste batean, eta halan danakaz. Lan hau astiz eta taldean egin genduen. Hiztegia horrela handi-handika sailkaturik, hurrengo lana berbarik gehienak eliminatzea zen. Orduan zetako jaso genduzen? Danen artetik interesgarrienak hautatzeko, hiztegi osoa hiztegi errimatu gisan jarteak ez baitzeukan onura praktikorik. Berba asko zeukan amaieratik asko mehaztuko zen eta gitxi zeukanetik gitxiago. Esaterako, GARRI atzizkian agertu ziren ehundaka berbetatik hamabost-hogei bateko hautua egin behar zen, ustez ohikoenak edo zer-



baitegatik interesgarrienak izan zeitekezenak hartuz. Mehazketa egindakoan, berba baliagarrien bilduma mugatu eta menperagarri bat gelditzen zen. Halan be, azken silabaren arabera, ondino moltzo handiegiak gelditzen ganera, sailkapen xeheago bat egin behar zen, azken bi silaben arabera, bestela ez baitzen bape errimategi baliagarria izango. Alde batetik sorta handiegiak eta errima aldetik laxoegiak geratuko ziren eta bestetik ez zen errimarako inongo aurrerapenik eskainiko.

Zelan batu baliagarritasun selektiboa eta aurrerapen aberasgarria? Horixe zen, oraingoan neuk bakarrean, pentsatu beharreko lan handia. Lan apasionantea, buruan buelta asko emotekoa, baina, pentsatu ahala, aurrerapena eta ezuste atseginak zekarzena. Beste hizkuntza batzutan izango ziren —eta badira— hiztegi errimatuak, baina ez nebazen ezagutzen eta nahiago neban halan izatea, ibilbide guztia neuk egingo baineban. Beharbada beste eredu bat aurrean nebala, arinago gauzatuko neban hiztegiaren egitura, baina zer irabazten neban gozamena eta denpora laburtuz? Oraingo hiztegi errimatuaren egitura, ia bere osoan, orduantxe erabagi neban. Zeintzuk kontsonante alkarregaz batu (B-D-G-R, K-P-T, M-N, S-Z-X, TS-TZ-TX...), azken bigarren silaban, bokalaz ganera, zeintzuk hots kontsideratu (S-Z-X, R, N, L...: SKA-SKE-SKI-SKO-SKU, NDA-NDE-NDI-DNO-NDU...) eta honelako kontuak. Berba batez, hoskidetasun edo hitzen materialtasunaren zehazpenik handiena, xehatze alperrekoraino eroan barik. Sailkatu eta zehaztu bai, baina beti be sorta konsistenteak gelditzeko moduan.

Sailkatze materiala eginik, sailkatze kategoriala geratzen zen, oso kontzeptu garrantzitsua berau, berba guztiak ez baitira maila gramatikal edo hizkuntz kategoria bardinekoak. Halan etorri zen aditzak, aditzondoak, izenordainak, adjetiboak eta izenak banantzea eta atzizkiak be aparte kontsideratzea, dauken garrantzi eta identitate bereziagaitik. Baina kategoria honein baitan be azpikategoria ezbardinak dagoz. Aditzean, esaterako, ez dira maila berekoak **etorri, dator, etor** eta **bat etorri.** Edo atzizki beraren

barruan, ERAn adibidez, ez dira adiera bardinak **galera, galdera**... eta **azalera, luzera**... Azkenean, Hiztegi Errimatuak lehen argitarapenean ekarri eban eta bigarrenean aldatu ez zen egitura burutuk gelditu zen.

Errima bakotxaren eremua eta banaketa garbi eukita, hiztegi guztia berridatzi behar zen, berba bakotxa zegokon kategorian eta azpi-kategorian ipiniz. Orduan agertu zen errima batzuk ondino ugaritasun gehiegi eta praktikan alperrekoa eskeintzen ebela eta, beraz, mehazte selektiboagoa egin behar zela. Beste batzuk, ostera, urriegi gelditzen ziren eta orduan hiztegiaren lehenengo zerrenda osotik hornitzen eta orekatzen saiatu behar zen, lehenago, kontsiderapen orokorrean, baztartutako berbak bersarturik. Halan be, errima batzuk askoz ugariagoak dira eta beste batzuk ez dago inondik be ugaritasunera ekarterik, hizkuntzak ez baitau, ahalbide guztiak sartuta be, gehiago emoten. Ugaritasuna murriz daiteke, baina ez urritasuna ugaritu. Errima Hiztegiak orduan euskeraren errima ahalmen orokorraren eta errima bakotxaren ikuspegi konparatiboki zehatza emoten dau. Azkueren hiztegiari lehen itzulia emoten hastetik Hiztegi Errimatuaren azken idazketara zenbat denbora joan jakun ez daukat gogoan, baina ziur urtebete eta bi baino gehiago izan zirela.

Gero, kaleratutakoan, argitaratzera heldu orduko, azken idazketa hareri gehitze txiki ugari egiten joango nintzen, Azkueren hiztegiak jasoten ez ebazen, baina euskeraz eta bertsolaritzan oso ohikoak ziren berbak sartuz. Honetan gehitze nagusia, kualitatiboki osoagoa, bigarren argitarapenak ekarriko eban. Jakina denez, Azkueren hiztegian oraingo euskeraren milaka berba aurkitzerik ez dago, batez be maileguak direnean. Aurkituko dozuz, esaterako, **ahaiko, lapiko, gerriko, ostiko, kokoriko, perretxiko**..., baina ez dozuz ikusiko **atiko, polipo, pronostiko, magiko, ziniko** eta abar. Hornitze eta gaurkotze hau Elhuyar Hiztegi Entziklopedikotik egin neban. Nahizta egitura bera izan, lehen Hiztegi Errimatuaren lehen edizinotik bigarrenera alde handia dago sail bako-



txaren edukietan. Hauxe da espetxean bertsolaritzaz egin neban lanik handiena, neuretzat eta beste edonorentzat balio zeikeena.

Izate eta etorkizun pertsonalari buruz, espetxeko urteak igaro ahala, geroz argiago neukan abadetzan ez nebala jarraituko. 1975eko agorrilaren 25ean urten nebanean, ez neban abadetza ofizialki izteko presarik hartu, hori kanpoko egoera ondo ikusitakoan egitekoa zela uste baineban, baina bai garbi neukan bertsolaritzan serioski saiatzeko erabagia. Senak edo barne konfiantza batek zinostan ez zela saiatze ustela izango, toki bat osotzea lortuko nebala baino. Nahizta temeritateen aurka preserbatzen nauen izakera euki, (koldarra eta bildurtia nazela esateko era elegantea), orduan ilusinoz eta kementsu aurkitzen nintzen.

Nire lehen saio publikoa 1976ko udabarrian izan zen, Gernikako Ikastolaren alde antolatutako jaialdi batean eta Jai-Alai pilotalekuan. Egun ha ez daukat ahazteko. Sei-zazpi hilabete igaroak ziren espetxetik etorri nintzenetik. Neure burua barriro mundura ekantzeko denpora behar izan neban. Abade egon nintzen herrietako eta inguruetako harremon ugariakaz gitxieneko kunplimen bat egiten egunak igarri barik joan jatazen. Franco urte bereko azaroaren hogeian hiltea gertatu zen. Aurreko urtean, ia hiltzat zegoela, haren hiletak aurrez ospatu genduzen espetxean, kartzelero katolikoen harriduraz.

—Zelan daiteke abadeak agonia bategaz horrela poztea?

—Poz santua! Heriotza ez al da negarraren erreinutik betiraun dohatsura aldatzea? Horixe opa dautsogu zuen Txit Jeneralari eta pozten gaitu laster Jainkoak bere tronuan betirako agintean ezarriko dauela pentsatzeak. ¡Viva Franco en la eternidad!

Baina Txit Jeneral txikia zuzpertu egin zen eta Jainkoak, beste behin gehiago, gure otoitzen porrota hobetsi eban. Hurrengo urtean eroan eban horraitino eta kanpoan ospatu ahal izan neban haren bizitza hobera pasatzea, nahizta orain ez nagoen guztiz segur muga harantz ala honantz pasatu eban.

## ESPETXETIK BUELTAN

Francoren heriotzondoak zelako mogida eta arrapalada ekarri eban maila guztietan ez naz hasiko azaltzen. Bestalde, herriko mogimentu burrukalaria bera be asko aldatu zen espetxera sartu ginenetik bueltarako. Aurretik nahiko uhol orokorra eta bateratua zen, ertz guztiak joez zetorren itsasgora bakar baten antzekoa. Urten nebanean, panorama zatitua aurkitu neban eta niretzat oso mingarria izan zen alde batekoen eta bestekoen tirakadak, zundaketak, errelezoak jasan beharra. Independentisten eta españolisten arteko tirabira bizi eta armin zegoen. Dana zen españolismoaren susmoa eta Zamorako espetxeak be, ez dakit zelan eta nondik, entzute hori hartua eban. Langile arazoari eta auzi sozialei garrantzia emoteak españolismoaren fardel ia automatikoa zekarren. Suspikazia gupidabagea zebilen alde guztietan zabaldua.

Nik nahikoa kokolo urten neban kanpoko egoerari buruz (linbotik zelan urtengo dozu, ba?), nire erreferentzia emozional guztiak espetxe aurrekoak baitziren. Lehengo taldeak zatituta, etsai bihurtuta aurkitu nebazen, batzuk alkarregaz berbarik egiten ez ebela. Biltzen nintzen zenbait lagunartetan nigazko mesfidantza somatzen neban. Beste batzutan neugatik biltzen zirela ohartzen nintzen, bilera bortxatuan, nire ingenuitatea ez mintzearren. Lehengo adiskidantzak eta taldetasunak hautsita somatzen nebazen. Nenbilen toki guztietan itaunketari aurre egin behar neutson, zer pentsatzen neban, norantz joten neban, zelako ideiak nekarzen. Zamoratik denpora luzea eginda zetorren lehenengo ordezkaria nintzenez, eta espetxe ha oso seinalatua eta nahiko popularra zenez, analista guztien xede bihurtu nintzen. Neure lehengo harremon guztietara gizaki aska barri soil baten begirada hunkiberaz hurbiltzen nintzen bitartean, eurek lehiaz bilatzen ninduen eta uste neban neure pertsonagaitik eta antxinako karinoagatik zela, baina sarritan ohartzen nintzen areago zetozela animalia politiko bat esaminatzera, lagun zahar eta lankide maite bat agurtzera baino. Hori



guztiz neureak izandako gune hurbil-hurbiletan gertatzen jatan.

—Kontuz horregaz, zer pentsakera dakarren argi ikusi arte!

—Kontuz Don Jabierregaz, ideia kutsatuekin urten dau-te!

Orduan, nire aurreko ibilgu hurbiletan, «Don Jabier» nintzen. Jabier izendunak ugari izanik, nitaz «Jabier» hutsa zinoenari sarri galdetuko eutsoen:

—Zein Jabier?

—Don Jabier!

—Ah! Gure lehengo abadie?

Oraintxe be holantxe bereizten nau askok nire abadetzako inguruetan. Badot gomuta berariaz hunkigarri bat, Gizaburuagako Esteban Bengolak, errepublika garaian alkate izan zenak eta gerrako eta gerrosteko zapalkuntza latza ez parkatzeko besteko sena zeukanak, esanari buruz. Kristinau kunplitzailea izan arren, ez zen bape katoliko beroa, frankismoagaz buztarturiko eleiza bihotzez arbuiatzen baiteban. Abade nintzela, nigaz isilpeko berba batzuk egiteko besteko konfiantza hartu eban, oso berba urriz eta neurtuz beti be. Espetxetik bueltan alkar besarkatzean, (hirurogeta hamar urtetik gora zeukan), dinost:

—Ondo etorrijje, Don Jabier!

—Esteban!! —hots egiten dautsot atzeraka—. Lehen beti «Jabier» zinosten da oin zatoz «Don Jabierraz»?

—Zu ontxe zara «Don», ez lehen.

—Ah! Horregaittik ixen bada, eskerrik asko.

Arestiko harira itzulita, «Don Jabier» izandako inguruetan be, gazte ekintzaileen artean, (asko neure eskolako eta dotrinako ume eta jolaskide izanak) badaezpadakoa nintzela susmatzea oso mingarri egin jatan. Espetxeko atetik urtenaz batera, geroago jakin nebanez, alde batekoak beren-beregi preparaturik etorri ziren, «beste aldekoen influentziak» harrapa ez nengian. Ezin neban iruntsi nire

abertzaletasuna dudan jar zeiten. Aluzinazino tropikal bat begitantzen jatan, zeinean ez nintzen pertsonalki aludíturik sentitzen, baina aldi berean hodeia buru ganean nabari neban. Franco hildakoan, alderdiak abiada azkarrean hasi ziren lehen hauteskunde demokratikoen suposamen hurbilerako prestatzen eta kokatzen. Abertzaleen artean, PNVren makineria abian zen eta bereak izango ez ginela joten eben izenak deskalifikatzeko, españolismoaren, komunismoaren eta horrelako mamuen amarrua erabilten eben. Baseak ez ziren gehiegi ohartzen (buruzagiak bai, horreik beti), demokrazia heldutakoan, jeltzaleak laster hasiko zirela independentzia errefusatzen eta espainolakaz eroso kohabitatzen. Orduan nire abertzaletasuna dudan jarri eban askori aurpegiratu izan dautsot geroago:

—Majo, eh! Ni orduen badaezpadako ta oin zeuek ultraespaiñolen sozijjo!

Baina honeik geroagoko kontuak dira. Une haretan abertzaletasuna ondino identifikazino orokorregia zen, beti be independentziaren aldezpen, formalki behintzat, esplizituagaz lotua. Batzuk orduan be ez ziren inondiko independentistak eta beste batzuk, egiz eta bihotzez zirenak, independentziaren kontzeptuan ezin eben eduki sozialik edo langile auzirik jasan, españolismoaren erpe mamuzkoak susmatu barik. ETA(V) eta ETA(VI)ren arteko haustura istilutsua gertatua zen eta abertzaletasuna berdefinitzen ari zen, baina horrek bolada oso agresiboa eta biszerala ekarri eban eta niri zurrunbiloaren erretxin-erretxinean kaleratzea egokitu jatan, kurumino guztiak airean zebizenean. Eskerrak ez nintzela atmosfera guztiaz jabetzen! Eguneroko harremon ugariak eta hain maila ezbardinetakoak hain arin zihoazen, ezen ezin neban bakotxaren akta oharturik jaso.

Beharbada bertsolarien kolektiboan aurkitu neban jarrerarik zabalena eta eskergarriena, han ez baineban akosorik sentitzen. Inork ez eustan konturik eskatzen, bai, ostera, ibilera barrietara laguntzen eta animatzen. Jente mota askogaz batera ibili beharrak



bertsolaria edegiago edo pasakorrago egiten dau kolektibo lez, nahizta politikoki beste edozein baizen alderdikoi izan ahal. Bertsolarien eguneroko ibilerak pertsonakaz gehiago tratetan dau ideiakaz baino eta horrek sortzen dauen tratu modua arnasgune freskoa izan zen niretzat eta bertsolaritzarako nekarren erabagia finkoago eta desiratuago izan zeiten lagundu eustan. Bertsolari batzuri, batez be garai haretan puri-purian zebizen Lopategi eta Azpillagari, hara-hona jarraituz eta euren babespean, bertso mundu aktibora hurreratzen hasi nintzen, areago entzule gisan, baina inoz neuk be kolaboratuz eta neure burua jente aurrean apur bat probatuz. Beti be informalki eta bide batez, argi baineukan nire debut publikorako ez nebala presarik hartu behar, astiro ibilita be, denpora arinegi zihoan-da.

Mundura berregokitze adabegitsu haregaz batera, askatasunak baeban alderdi hunkigarri ugari: hainbeste aldiz amestutako natura amaibagea, bere nostalgia berreskuratu guztiakaz, eta batez be pertsonak, ezagunak eta barriak, lehengo umeak gazte bihurtuak, gazteak heldu, asko ezkonduak euren ume barriakaz, heriotzak eroanak be bai, euren artean gure aita, bera barik etxeari eta etxe inguruari antzik hartu ezin neutsona. Emozino asko eta askotarikoak, batzuk bortitzak, beste batzuk oso samurrak eta ez gitxi kontradiktorioak. Emozinoak be hagoatu egiten dau. «Hau lar dok, bat batien asimiletako», pentsetan neban. Lanen bati heltzeko ordua iritsia zela ikusirik, burua apur bat deskonektatzeko, basoan hasi nintzen koadrila bategaz, apeaginan. Burua deskonektatzen eustan, baina bai gorputza absorbitu be. Bizi guztian behar hareitan zailduak zegozen lagunen ritmoari jarraitu ezinean ibilten nintzen, harein indar eta trebetasun barik. Orduan apeak zuritu egiten ziren eta haxe izaten zen nire besteekiko diferentzia apalgarria gehien nabarmentzen ebana. Lagunek ehun apea zuritzen ebezen bitartean, ni ozta-ozta iristen nintzen hirurogeta hamarrera, ahalak eta bost eginda. Alperrik lotsatzen nintzen, preso egotea desiatzeraino, han martxari jarraitu beharra baitzegoen. Egi-

ten nebanaren arabera kobratzea proposatzen neutsen, baina ez eben onartzen eta euren buruei beste ordaintzen eusten, eskuzabaltasun larregiz. Asko eskertu neban lankide harein konprentsinoa eta, niretzat lan gogorregia gertatu arren, bolada harek giza marka iraunkorra itzi eustan sentimenean.

Nire bertso debuta 1976ko udabarrian izan zen. Data ez daukat gogoan, baina apiril aldera izango zen, Gernikako ikastolaren aldeko jaialdian. Oskorri taldea eta sei bertsolari ginen, Abel Muniategi gai jartzaile zela. Bertsolariak Lopategi, Azpillaga, Jose Lizaso, ni neu... ez daukadaz danak gogoan. Oso antolakuntza onaz ganera, sarrera asko aurretik salduta zeukezen eta Jai-Alai pilotalekua lepo bete zen goi eta behe. Motiboa eta kartela deigarriak izanik, ez ziren gitxi nire debutaren ikusmiran inguratuak. Segurrenik bestela be etorriko ziren, baina egun haretako ikusmin nagusia entzule askok nigan zeukan. Jaialdi beroa izan zen, postfrankismo hurbileko tenperaturaren arabera. Baita arreta atezukoa be, gorago aitatu dodazen arrazoien kariaz. Nik han kantatutako bertso batzukaz Oskorrik kanta bat egin eban gero. Entzule mordo batek kontua eroan eban zenbat bider kantatzen neban «Euskadi» eta zenbat bider «langile», hurrengo egunetan berehala jakin nebanez. Xehetasun honek garbi adierazoten dau bai garaiko giroa, bai bertsozale askoren nigazko jarrera. Orduan ez neutson intriga anekdotiko baten esanahia besterik emon, baina gerora ohartu nintzen debutetik bertatik atxiki jatala geriza kontradiktorio bat, begikotasun sutsuenak eta begigo irreduktibleenak (honeik gehiago hareik baino) erakarriko ebazena. Kostata izan bada be, dagoeneko ikasia dot, edo etsia naz, geriza horregaz bizi izaten.

## Etxerik etxe

Bitartean ondino ofizialki abade nerraien, baina ez niharduen abade. Gizaburuagan eta Amoroton lehenengo agerpenetik azaldu neban denpora bat behar nebala neure burua eta neure eginkizuna barriro munduan kokatzen eta egoteko trankil, eguna heldutakoan, garbi adierazoko neutsela-ta. Herri bietako etxeak eta baserriak banan-banan bisitatu nebazen eta egunean zenbat emozino kargatzen jatan ez dago esaterik. Etxe guztietan harrera ezin xeratsuagoa prestatzen eben, bazkari edo afari apartekin, eta jira neuk uste baino askoz gehiago luzatu zen. Gizaburuaga ez da herri handia. Orduan berrogei bat familia izango ebazen. Amoroton, ostera, hirurehun bizilagunetik gora ziren eta pare bat hilabeteko lana hartu neban, etxe bakotxean kontuak luze joaten baitziren. Espetxeko barriak, xehetasunak, tunela, motina, gose grebak, hango bizimodua... dana hurretik eta astiro entzun nahi eben. Neu be emozionatu egiten nintzen, etxeetan bizilagun barriak, umeak, ikusiz, lehengo nire gomutako neskato-mutikoak neska-mutil galant eginak, lehengo neska-mutilak ezkonduak, eta halan. Zenbat kontu esateko, galdetzeko, berba egiteko! Etxe bakotxetik alde egiteak pena emoten eustan, eurek be denbora luzeagoa nahi eben, baina halan ez neban hasitako jirarik sekula burutuko eta, behin hasi ezkero, amaitu beharra zegoen, ez baineban etxe batzutara iritsi eta beste batzuk hain barik izteko barrurik izango.



Familia guztiak banan bisitatzeaz karga handiegia hartu neban, astebetean egitekotzat inozoki pentsatu nebana hamar bider gehiago luzatu baitzen. Etxe guztietan kontu bardintsuak kontatu behar nebazen, galdera bardintsuak egiten eustezen, eta azkenean emozionatzeko gauza ez nintzela nengoen, emozinoa be, luzatua eta errepikatua, akigarri baita. Gizaburuagaz eta Amorotoz ganera, baneban beste hamaika leku, etxe eta lagun bisitatu beharra, neure jaioterri Etxanon eta Zornotzan, neure senitartekoak, preso geratu zirenen familiak, kanpoan ziren preso ohiak, lehengo abade lagunak, eta hainbat eta hainbat ekintzaile eta maila guztietako lagun. Zabalegi hartu nebala beluegi konturatu nin-

tzen bolada trinko ha amaitu zenean, Aramaioko Untzilla auzoko Uxarte baserri-tabernan igaro neban hamabostaldi bat, Lopategiren bitartez egindako harremonari esker. Inguru ezagunetik aldentzera joanik, han be lagun eta ezagun barri piloa egin neban.

# 6. Bertsolari atipikoa

## ABADETZARI AGUR

Ez dakit zenbat denporara, azkenean Gizaburuagan eta Amoroton azaldu neban abadetzan ez jarraitzeko erabagia, gehienek itxaroten ebena. Artean, abade lanik ez egiteaz ganera, eleizarako debozinorik nekez ikusiko eusten eta jarraitzera ninoala entzuteak harrituko ebazen gehien. Herrira agertzen nintzen aldi ugarietan, meza orduak ekiditen ahaleginduko nintzen, ni ez eleizaratzea inoren mingarri gerta ez zeiten, baina kristinaurik kokoloenak be usaina hartua izango eban. Abadetza izteko erabagia iragartean, garbi azaldu neban, sinestunak ez mintzeko moduan, nire eleizagazko jarrera, baita, orohar, erlijioagazko be, eta garbi itzi neban, ondino be halan daukadan moduan, ez neukala ezelako damurik abade izanaz, aitzitik, ostera, abadetzako urteak (ez hainbeste seminariokoak) nire bizitzako jorienak eta apasionanteenak izan zirela eta nire munduko zorterik handienetakoa Gizaburuagan eta Amoroton, eta orohar Lea-Artibai guztian, hartu neban eta eurekiko geratu jatan karinoa izan dela. Handik urteetara, lerrook ezin dodaz begiak hezetu barik idatzi.

Hirurogeta hamazazpian-edo eskatuko neban sekulartzea pozik emon eustela uste dut, tramitazinoan erabili eben bizkortasunetik. Gerora sekulartze prozesuak asko zaildu ei dira, baita sarritan ezindu be, komeni ez jakezenak kanpoan ginela ikusi ebenean. Espetxetik itzuli nintzenerako, Bizkai aldean behintzat, abadeen desbandada izugarria gertatua zen. Orain gelditzen diren nire ikaskide banakak «abade gazteak» dira. Pentsatzen hasita nago, aguretzen nazenean, «gazteria» horretara erretiratzea, gastuak neuk

ordainduta bada be. Latin ahaztua maite dot, sakristi usainak ez nau higuintzen, eleizpeak eserleku handiosak iruditzen jataz, euren harlandu isilez eta zureria ikusgarriz. Bazterren batetik fede apurren bat hornitu ezkero, zer behar da, Jainkoa ona dela predikatzeko?

Bertsotan, lehenengo plaza egin nebaneko, abiadura izugarrian sartu nintzen. Bat-batean eliteko ibileran aurkitu nintzen, deiak edonondik. Martxa handiegia gaineratu jakon nire trebetasun dana beharrekoari, baina, honetan eta beste arlo guztietan bizilege denez, aukerak trebetasunaren ondorio direlakoan, sarritan trebetasuna ez da halabehar saihesgatxera egokitze bat besterik. Horreri ustez trebea zaren jardunean arrakastarik eza gehitzen badautsozu, bokazinoa delakoaren karikatura hozkaria aurkezteko moduan zagoz. Abiadura bizia eta bizigarria, dirua ikusten baineban. Espetxetik aldeko hutsen jabe urten neban, eurak be nahikoa zigortuak. Etxea eta jana baneukan amarenean, baina mogitu beharra zegoen. Berriatuko Arregi «Altzu» bertsolariak Dyane zahartxo bat itzi eustan, auto barria erosi arte.

—Nozko erosi al ixengo ete jjoat nik autotxu bet!

—Hau dabillen bitxartin, ezteukek erosi biherrik.

—Mesede handijjeijje eztok hau?

—Mundu honetan txikijjek etxok ezetako balixo.

Auto hari hamaika tarratada gozo atara neutson bide zabaletan eta estuagoetan. Gidatzea oraintxe be gustatzen jat eta orduan zorabiatu egiten ninduen, umetako fantasia bat, sekula eskuratzerik pentsatuko ez neukeena, bolantean baineroan. Karneta be orduantxe estrainatu neban, espetxera aurretik justu justuan atarea. Lekeitioko Gabika autoeskolan presaka genbizen. Bigarrenean aprobatu nebala uste dot, zeina huts egin baneu, han geratuko zen nire karneta. Paperak eskuratu aurretik, barruan gengozen. Autoeskolako ugazabak, grebakide eta espetxekide genduen Alberto Gabikaren anaiak, bazeukan harritzeko motibo gehigarri bat:



—Orduan zetako ibilli da Gixaburuko abadia karneta etaraten?

Gero ederto etorri jatan. Altzuren «Dyane» zaharrari Euskal Herria korrituazo ondoren, amak «Dyane» barria erosi eustan eta ha zen nire zoramena. Bertsotan hasitakoan, dirua be inoz ez lez ikusten hasi nintzen. Orduan saioko lau mila pezeta edo izango zen. Bueltan mesanotxeko kaxoian izten nebazen milakoak eta, hirulau saioren buruan, sorta potolotu egiten zen. Goizaldeko orduetan, ohaburuan jesarrita, patrikatik atara barriak moltzora gehituz, milakoak banan-banan kontatzea, behin eta barriro, loguraren lorratz barik, aluzinazinoa zen niretzat. Halako diru... Halako diru «errezik» esatera ninoan, baina, «errez» hori kenduta, geroago azalduko dodazen arrazoiakaitik, dinodan halako diru etorririk ez nebala inoz ikusi, hogeta hamabost urte soinean euki arren. Saio ordainduez ganera, ostantzeko ekitaldi militante eta laguntzaile guztietarako ekimenek nigan partaide inkondizionala ikusi eben eta denpora ia berehalakoan garaiko jardun zurrunbiloaren erdian ninoan, abiaduraren kontrola galduta. Egia esan, pentsatu be ez neban egin kontrolatzerik, bakotxak ahal dauena emotekotan, nire ekarpena hortxe ikusten baineban. Gaztetxoa antxina izana nintzen arren, ilusinoz eta adorez niharduen.

### AMORE EMOTEAR

Baina bertsolaritzan ez nenbilen bape eroso. Egiten nebazen saioetan, entzule aurrean, nahikoa gailen urteten neban. Areago ondino, betiko begitan hartu ninduen sektore muzintiak (eta handi samarrak, batez be esfera eruditoetan) izan ezik, entzuleriak nintzen baino potenteago ikusten ninduela nabari neban. Saioetan irudi ha emon arren, aurre-osteak larriak ziren. Bizpairu egun lehe-

nagotik hasten nintzen artegatzen, ondoezten, loa galtzen, saioa burutik kendu ezinik. Eguna iristean, larritasunaren piztia krudelki handitzen zen nire baitan, jateko gogoa be berak irunsten ebala. Saio aurretik afaria antolatzen baeben, disimulatu ezinik ibilten nintzen, etxean janda edo eguerdian ondo bazkalduta etorri nintzela-ta. Segurrenik ezer jan barik heldu izango nintzen eta eguerdia erdi pasoan joan izango zen. Nire zintzurrak ezin eban ezer barruratu, piztiaren burua saman baineukan. Saioa amaitzean, enboskada batetik libratuta lako lasaitua hartzen neban, piztiak barreka alde egiten eban, «laster arte» esanez eta nik «izorra hadi» erantzunez, orduantxe gozatzen neban lagunartean, lekuan lekuko harremon barrietan, etxerako sekula presa barik. Heltzen nintzen orduan heltzen nintzela, nire loak Anbotoko Atsoaren erratzera ihes egingo eban eta mesanotxeko diru kontatzea eginkizun erdi ritual erdi adiktibo bihurtu zen. Milakoak astiro eta ferekuz pasatu ahala, pentsatuko neban:

—Politték zarie, baia ez kosta bakoak, barrabanok! Karatzelan hainbeste urte eindde gero, sufrikarijjo honetara kondeneu biher ete jjoat neure burue?

Ez nintzen trantze gorriak ikusten ohitu bakoa eta bizitzagazko baneban lehenengo esturan ez amore emoteko beste eskarmentu eta sosegu. Larritasun hareik normaltzat jo nebazen bertsolaritza lako jardun eskegi samarrean. Beste bertsolariak be hortik pasatuak zirela entzuten neban eta batzuk, kontundentzia inpresinogarriz nik uste, «larritasun horrek hil arte jarraituko daua» esanez animatzen ninduen. Pentsetan neban:

—Larrittasune hain zer pertsonala ixenik, zelan konparet'ozak bere handi-txikijjek? Azkenien erreferentzi bakarra nobere buru'ok. Katilluen zein itxosoan, ittotie beti ittote.

Denporari joaten itxi neutson, luze, presa barik, zaildu-ko nintzen segurtasun osoz. Gorputzak eta buruak nahitaez gara-



tu behar eben mekanismo neutralgarriren bat. Beti izan dot nire ganetik doan naturagazko sinesmen fatalista samar bat, zeinaren arabera ni ez nazen soinean daroadan (edo naroan) izatearen sentitzaile hurbilena besterik.

—Ikesik'ok ibiltten, holan sufridutie heuri komonidu jjak gitxien-da! —esaten neutson neure buruari, solaskide nigandik argiro bereiztu eta enfrentatuari, eta bere esku izten neban gatazkaren konponbidea. Egingo zen azala. Ez neban neuk egingo, bera egingo jatan. Hilabete batzuren buruan, ustez epe arrazoizkoa gainditua zenean, ez neban aurrerapenik nabari eta zeozer erabagi beharra zegoen.

—Ez haz hil arte larrittasun honen menpien bixiko, eztok? Ez haz, espetxeko tunelgintzen lez, urtenbide posible bakarrari kinki tte kanka ibilliko, eztok? Bixitziek norabide asko jjekozak eta ondiño hautatzeko unien hao. Bertsolaritzie nahikoa aprobeu'ok. Hau eztok hiretzat! Eztok eta kittu!!

Honelako erabagiak ez dira egun batetik besterakoak izaten, aste luzeetan arrastatzen den prozesu gorabeheratsua baino. Behin «gaurkoa azkena», behin «beste batekoagatik jarrai dagidan», batean «bahoa gaindituz», bestean «kakazaharra!». Azkenean norantz erabagiko den presentitzen dozun zalantza baino sentipen zapalgarriagorik ez dago. Eta azkenean bertsolaritza lagatzea erabagi neban. Hartuak neukazen konpromisoei eutsirik, barriei ezetz esaten hasi nintzen, benetako arrazoia adierazoten ausartu barik. Zelan behar neutsen nire erabagia azaldu telefonoko dei gehienetan ezezagunei? Ezin nebala esanda konpontzen neban unea. Barriro nahaspila etsian lerratu nintzen, erabagia hartzea baino gatxago egiten baijatan haren barri emotea. Nonor, zeharka eta disimulu osoan, bertsolaritza izteko posibilitateaz tentatzen nebanean, erantzuna borobila zen:

—Zoratute hao ala? Pentsetie be holakorik!

### BERTSO JARRIETARA

Entzule edo galdetu posible guztien ahoan errefus guztizko berbera irudikatzen neban. Pentsatzea zorakeria bazen, erabagia bera zelan kalifikatuko ete eben? Burutapen irmoa zen, ostera. Horretan ez neukan zalantzarik. Erabagiaren irmotasunaren eta publikatzeko ausardiarik ezaren bitartean, erdibide bat otu jatan: bertso jarriei bakarrik ekitea. Artean bertso jarrien izaeraz oso jabeturik eta gustaturik nengoen. Baneban zenbait bertso sorta, espetxeko bizitzari buruzkoak eta abar, lagunartean kantatzeko sarri eskatzen eustenak eta gogoz entzuten zirenak. Orduan pentsatu neban:

—Zegaittik ez bertso saiojjetan jarrijjek kanteu? Horrek beste sorta barri batzuk eittera bultzeuko najjok eta urtebetien sekuleko repertorijjoa eukiko jjoat.

Halantxe hasi nintzen bertsotarako zetordazen deiak bertso jarrien modalitatera bideratzen. Ez neban esango bat-bateko bertsogintza iztera ninoanik, bertsogintza jarria aprobatu gura nebala baino. Gogoan dot Iurretako San Migeletako saio bat, pilotalekua bete beterik. Sei bertsolari ginen kartelean eta, nortzuk zehatz ez bada be, badakit Agirre ondoan neukala, egin eustazen iruzkin batzukaitik. Besteek bat-batean ohi lez kantatu eben eta nik, ez dakit txanda bakarrean ala bitan, bertso jarrien sorta bi edo hiru kantatu nebazen. Entzuleek gustura entzun ebela begitandu jatan, segurrenik nire erabagi ezkutuak begintantzino haxe behar ebalako. Halan be, argi zegoen bertso jarrien eta bat-batekoen ingurugiroa oso ezbardina zela.

San Migelak irailaren azkenetan izaten dira. Udabarrian debuta egin nebanetik, sei bat hilabete neroazen kantuan eta horreitako azken hilean edo azken bietan bertsolaritza izteko katramila nerabilen buruan. San Migeletan, erabagia betetzen ari nintzen. Ez zen, beraz, haizeak ekar-eroan ohi dauen buruera txakil bat. Entzule ezagun eta lagunen arteko iruzkinetan, eta batikbat bertsolarien artean, ez neban nire erabagiaren benetako alkantzua argi jakinazoten, baina neure kautan guztiz ziur nengoen nire bat-bateko bertsogintza historia joana zela.



Ez zen, ostera, samurra izan eta ez zen izan, neure koldarkeriagaitik. Mentalki hain sendo eta argitasunez hartzeko gauza nazen erabagiak burutzeko kemena labur geratzen jat gero eta horrek ezbai sarritan deprimentera lerratzen nau. Deiek jarraitzen eben. Jaialdiez beste dei mota batzuk be ugari ziren, hirulau bertso botateko okasinoak: mitinak, presoen harrerak, manifestazinoak, zerbaiten aldeko ekintzak, orduan hain ugari ziren langile grebak, era askotako bilerak... Neure urteetako konpromisoaren harian zetozen dei honei guztioi zelan esan behar neutsen ezetz? Baina honeitan kantatzen baneban, testimonialki bazen be, zelan albo egin ostantzeko saioei? Non jarri behar neban berez egon be ez zegoen marra banatzailea? Okasino batzuk oso serioak eta zehatzak dira, baina beste batzuk, kausadunak izan arren, informalago joan ohi dira eta sarritan, ekitaldiaren une batean, umore kutsua hartzen dabe, edo ezarri gura izaten jake behintzat. Halako batean bizpairu bertso kantatzen entzun zaituenari zelan azaldu behar dautsozu bestelako jaietan ez dozula kantatzen?

### ATZERA BUELTAN

Bestetik bertso jarrien eskeintzak ez zekarren nik uste neban lako tirarik. Uste esan dot, baina gura hobeto, ze uste-uste, banekusan oso gatxa zela bertso jarriak bat-bateko saioaren barruan egoki etortea. Horrela, bertsolaritza izteko erabagiaren aurreko zalantza baino zurrunbilo lorrinagoan nenbilen. Ibaitik kanporatzeko ez nintzela gauza ikusirik, azkenean uholak eroan nengian itzi neban, pentsatuz:

—Da zer? Iñok etxakik ezer. Iñok etxok ezer someu. Heure kauteko denporale bat ixen dok dana. Viva Rusia!

Deiei atzera baietz esaten hasi nintzen eta bertso jarrien konturik ez neutson gehiago inori aitatu. Horregaz ez zen, noski, ezabatu prozesu guztiaren abiarazle nagusia, bat-bateko bertsogintzaren larritasun ni baino indartsuagoa, eta pentsa zeitekeen neure koldarkeria konprobatuan are hondatuago geldituko nintzela. Larritasunak berean jarraitzen eban, mendekatiago behar bada, jasanazo neutson fartsagaitik, baina nire ganean dabilen naturak ezintasun biren artean konponbide bat aurkituko ebala sinesten neban. Neu ez banintzen kinkatik askatzeko gauza, berak ez zeikeen bere burua betiko larritasunera kondenatu eta halantxe hasi zen nire pentsamena kinatzen.

—Ixteko ez bahaz, eutsi ein biko'tsek!

—Da zegaittik ez? Katakunek gozak ala?

Urtenbide honeri sinespidea emotea erabagi nebanetik, larritasuna geroz gaindigarriago joten neban, ez benetan gainditzen ari nintzelako, alderantziaren ezina konprobatua nebalako baino. Bitartean denpora aurrera zihoan eta ni haren ganean, albora egin ezinak aurrerantz bultzatua, eta larritasuna urduritasun bihurtuz zihoan eta urduritasuna be bazihoan oskolduz, biziraupenaren minimoetatik despegatzeko moduan, nozean behin, hotzarena ala bestearena ete zen dudan, barriro larritzen banintzen be. Gerora ohartu naz auzia ez dela tentsinotik libratzea, bera zutaz barik zu hartaz baliatzeko defentsa sistemaz hornitzea baino. Zelan lortzen den? Hori nire ganean dabilen naturari galdetu beharko, baina apenas argitasun handirik emongo dautsun, bere kontzientziarik hurbilena nazen neuri be ez daust esplikazino handirik emoten-da. Derrigorraren legea trebetasunaren garatzaile aurkezten dautsu eta ganerakoan hor konpon. Edo lehertu edo aurrera zoaz. Eta badirudi nahikoa lege efikaza dela. Saio egunetan normal samar jaten ikasi neban (botaka sekula ez dot egin, batzuk ikusi izan dodazen lez), eta saioan bertan be neure burua polito menperatzen neban. Horretarako, pentsakizun adoregarri bateri hutsik barik eragingo neutson bidean:



—Tirok, txotxo! Bixi guztijjen da oin baiño berdiao hengoala, iñoz gerteu bakoa geur gerteu biher ete jjak, ba? Zientzi estadistiko guztijjek heure alde dekozak.

Zein zen inoz gertatu bako bildurkizuna? Jente aurrean eta bertsoaren erdian taket gelditzea, ez aurrera ez atzera. Une batean ezerezean aurkitzeko posibilitate prebenigaitzak deskonposatu egiten ninduen, ez bainenkien nondik aurrea hartu. Hemeretzi urtegaz lehenengo bertso saioa entzun nebanean, Bizkaiko hirurogeiko finalean, denpora gehiena buruari helduta igaro neban, hasitako bertsoa amaituko ete eben larri. Larritasun ha gero neure buruaren kasura biratu zen, baina, behin zientzia estatistikoz, behin «hartu daiela popatik» erronkosoz, behin buruak emoten eban edozein edozerkeriz, nire ganeko naturak lortu eban astiro-astiro saioetara lasai antzean ez ezik, oilar samar aurkez neinten. Hortik oilategia dominatzera jauzi erreza zegoen.

Barne prozesu guzti honek zenbat iraun eban ez dot datetan zehatz gogoratzen, baina badakit luzea izan zela, gitxienez urtebete. Sarri pentsatu izan dot, erabagi ha aurrera eroan izan baneu, orain zer historia kontatzen ariko nintzatekeen, baina beranduegi gogoratu naz. Bizitza aukera anitzen arteko hautua zelakoan, probabilitate ihesiek eliminazinoz itzi dabena nazela iruditzen jat askotan, nahizta, zorionez, geratu dena ez den hain erdeinagarria. Ausartago izan banintz, segurrenik oraingo hilda nengokeen. Ohartzen naz bidekurutze askotan abandonatu dodan norabidea ez dela izan jarraitu dodanaren hobespenagaitik, itzitakoaren bildurragaitik baino, eta horrela emon daike nire bilakaera hobespenen galtze baten eta bildurren pilatze baten erresultantea dela, baina ez da hainbesterako. Nire ganetik dabilen

naturak hori baino freskoago kontserbatu nau, bere onagaitik segurrenik, ez nireagaitik. Azkenean, zeuk daroazula zein berak zaroazela, bidea beti da ibilkizun, baztarra joten ez daueno.

### «TORREBURU» ALA «ETXANO»

Bertsolaritzan jarraitzeari buruzko zalantzaldi luze haren barruan, beste bidekurutze bat be galdu neban, xumeagoa izan arren, nire izatearen gune txit sensiblea jo ebana. Neure jaioterriaren izena hartu gura neban: «Etxano». Abadetzan «Gizaburuagako abadea» edo «Amorotoko abadea» izan nintzen eta ondino halan jarraitzen neban. Poz emoten eustan nire izena bizitzan hain garrantzitsu izan dodazen herri biokaz lotuta ikusteak. Halan be, lehenago, nire izatearen sustraietan, neure jaioterria zegoen. Jaiotetxea be han neukan, «Torreburu» izen solemnez. Duda luze samarrean egon ondoren, etxearen izenari intimoegi neritxon izen publikotzat, eta bera be jaioterriaren barruan sartzen zela pentsatu neban. «Etxano» niretzat jaiotetxea, auzoa, beste auzo batzuk, gure mendia, beste mendi batzuk, eskola, eleiza, eleizaldea... nire umezaro eta gaztaro guztia zen. Nire izatearen elementurik iraunkorrena, neure jatorria. Bestalde, Etxano Iparraldean be ikusia neban eta hein batez Etxahunegaz zerikusia aurkitzen neutson. Nire umezaroan Etxano udalerri zen, gero Zornotzak edo Amorebietak beragandu eban eta gaur Amorebieta-Etxano udalerria osotzen dabe. Nire ezizentzat Etxano erabiltea samurrago, hunkigarriago egiten jatan.

Nonork eragotz leike norbere abizena baino pertsonalagorik eta barnekoagorik ez dagoela, baina euskaldunek abizenari apenas izan dautsoen laztan handiegirik, artegatzeko motibo ziren paper eta agirietan izan ezik. Kale kulturak erremedio barik galtzera daroan arren, gaur be euskaldun asko etxearen izenetik ezagutzen dira. Baita herriarenetik be, bizilekuz aldatzen direnean. Ezagutzen dodaz «Elorrio», «Otxandio», «Maume», «Morga» eta honelako hainbat, batzutan herri izena hutsean eta beste batzutan bere izena aurretik dabela: «Santi Morga», «German Maume», «Sabin Orozko», «Txomin Etxano» eta abar. Etxe, auzo edo herri, badirudi euskaldunengan territorioa behinagoa izan dela izate indibiduala baino.



Nire kasuan, baneban neure abizenean samurtasun handirik ez ikusteko arrazoi gehigarri bat. Hamaika urtegaz komentuko eta hamabigaz seminarioko samaldan sartu nintzenean, «Amuriza» zenbaki baten identifikazinoa edo alfabeto ordenako posizino bat zen. Ez nau mintzen zenbakiak, nintzen gorena bera izanak baino. Espetxean be bardin gero. Abizenak zenbaki errukarri bat edo preso izorratu bat nintzeneko asoziazinoa zekarren. Nonon ezustean «Amuriza!» entzuten baneban, ikara puntu batek joko ninduen edo burua besterantz okertuko jatan. «Torreburu» edo «Etxano» entzutean, ostera, burua eta sentimentuen karga guztia harantz biratuko jat. «Eh? Nor ixen dok hori? Nok esan jjok hori?». Hortik aurreranzko berbak soinu bihozberan, irribarre gaztetuan joango dira. Nire abizen publikoa «Etxano» izango zela erabagi neban eta, izen eta guzti gura baeben, «Xabier Etxano».

Bertsolari batzuk zinosten beranduegi zela, «Amuriza» deitura hedatuegia eta markatuegia ei baitzen, orain aldatzen hasteko. Neuk be banenkien, baina asmoa aurrera eroan neban. Saioetarako deitzen eustenei esaten neutsen Amuriza barik Etxano ipinteko. Batzuk tematu egiten eusten, Amuriza ezaguna baitzen eta Etxano ez baitzen inor. Telefono harremonak laburrak eta eliptikoak izaten dira eta, atoan ulertzen ez badau, ez dago mehatxu tonua natural jausteko modua prestatzerik eta, batean deitzaileari ahaztu jakolako, bestean kartelak eginak edo beste batek egitekoak zirelako, edo egunero gertatu ohi diren oker txiki izenbako horreitako edozein zelako, azkenean nahi ebena ipinten eben. Leku batzutan lortu neban Etxano ager zeiten, baina gero saioan bertan aurkezleari edo gai jartzaileari asko kostatzen jakon

Etxano esatea. Bertsolariek eta beste lagunek, barriz, euren Amurizagaz jarraituko eben. Behin Iurreta inguruan, ez dakit zein auzotan garbi, surzapal batek eupada egin eustan:

—Da, Etxano? —Eta gero: —Hi, Etxano!... Zer diñok, Etxano? —eta horrela jarraitu eban.

—Joño! —pentsatu neban, zirraraturik—. Eztok, antza, eziñezkoa!

Bolada batean nahasmenak eta bekoskoak bidezko iruditzen jatazen. Gitxiago jasaten neban, erabagia tematzen eustenean:

—Hori zelan eing'ok, ba? Ez habil bape errezoiko.

—Hi! Ni enajjabik errazoiek emoten, neure gogoa erakusten baiño. Ixena noren'ok?

—Ixena heurie ixeng'ok, baia bestiontzat hi beti ixengo haz Amuriza.

—Ikusiko jjuk.

Azkenean ez zen ezer ikusi. Zarrapastada bat besterik ez zen izan dana, amore emon baineban. Beste lorrin bat gehiago nire giza ondarean. Auzia berez ez zihoan aurrera eta sakaka ekiteko gogoa joan egin jatan. Kemenik ez nebala izan esateko modu bat. Orain «aspertu naiz» esaten jako zeozeri eusteko irmotasunik ezari, aspertzea ekintza positibo bat bailitzan. Ni be «aspertu nintzen», hots, «alpertu nintzen» eta nire Etxano hunkigarria bere nostalgian geratu zen. Askotan gertatu jat ilusino osoz abiarazotako planei gero sakatzeko adorea faltatzea. Ez naz aspertzen, desgogotzen baino. Beranduegi hasi naz porrotera destinaturiko inpultsoak galgatzen. Hau guztiau ez dinot aholku asmoz. Gaztetasunik ez dago, gaztetasunak baino. Horregaitik barritzen doguz bakotxak aurrekoen oker gehienak. Gaztetasuna balitz, esperientzia transferiblea geunke, gazteak gorrotoen dauen kontzeptua, hain zuzen. Ahalbide bakarra da, okerrak zuzentzen ikasterako, gaztetasuna ez daitela joana izan. Sasoiz iritsi nazela uste dot.



—Astiro, hi! Ez hai oldartu! Ez eik gero etsi biherrak zapalduko hauen amesik abijjeuazo!

Sakada heroikorik barik, euste minimo bat nahikoa izango zeukeen izen aldatzea burutu izan baneu, gaur danentzat «Etxano» nintzateke, iretargikoentzat barru. Zorionez, ames guztietan ez dot porrot egin, baina hondakinetan irabazi dodala uste dot eta hortxe etara dot daukadan temoso fama.

## MENDITIK MUNDURA

1977. urtean neure lehen liburu izenduna argitaratu neban. MENDITIK MUNDURA. Artean bazen beste bat, HIL ALA BIZI, espetxetik isilpean etarea eta isilpean argitaratua, «Larraun» ezizenez. Liburu hau espetxetik kanporatzea abentura handia izan zen eta gogoan dot, esku onetara heldua zela segurtatu ginenean, zelan ospatu genduen bazkari aparteko batez. «Hil ala bizi» elaberria zen, konnotazino politiko argiak zeukazena, espetxean bizi genduen egoeraren arabera. Distantzia handiagoa har neikeen, baina zegaitik hartu behar neban? Literatura egiteko, zenbait hurbiltasun ideologiko difuminatu egin behar direlako teoriak maiz entzun dodaz, baina ez nabe konbentzitu. Auzia ez da hainbeste zein distantziatan jartzen zaren, dana dalako distantziatik produktu ona ala txarra sortzea baino. Tonu panfletarioa bera be jenero bat izan daiteke, era artistikoan egitea lortu ezkero.

«Menditik mundura» espetxetik ekarri nebazen idazki solteen bilduma da, erdiak inguru poema gisakoak eta beste erdiak bertso sortak. Karpeta zaharretan neukazen zirriborroei orraztu bat emonik, liburu bat osotu neikeela pentsatu neban, kanpoan nintzela egindako zenbait gai eta bertso erantsita. Eta izena «Menditik mundura» jarri neutson, niretzat bereziki esanguratsua. Izan

be, nire jatorria, baserrikoaz ganera, mendikoa da. Gure etxea Bizkargitik Oizerako mendilerroaren erdian eta gan-ganean dago, iparretik Gorozika, Ibarruri, Mendata eta itsas alderanzko mendiak bistan dituela, eta hegoatik Etxano, Zornotza, Durangaldea eta Gorbeialdetik Bilbo ganera eta Santanderrerantz ikuspegi amaibakoa. Ez da mendilerro altua, baina gorago ez dago ezer, urruneko gailurrak izan ezik, eta honeik, distantzia batera, parean edo beherago emoten dabe, batez be bere inguruaren nagusitasuna handitzeko inozentzia daukan umearentzat.

Torreburutik itsasalderantz, Gorozika, Ajuria, Mendata urrunean, eta auzo eta baserri solteak ikusten dira, baina danak be moltzo txikiak, neure bizigiroaren araberakoak. Hegoarantz, Etxanoko elizaldea ezkutuan dago, beste auzo batzuk ezker-eskuman eta urrunean agiri dira, baina, oro har, paisaia gehiena mendia eta basoa da. Bistan dagoen herri handi bakarra, eta bera be erdizka, Zornotza da, oinez ordubeteko bidean. Beste herri batzuk be banenkien han zirela, Durango, Lemoa, Arratiako guztiak, Galdakao, Bilbo, Larrabetzu eta Txorriherriko herriak, eta urrunagoko mendi artean egon zeitekezen danak, baina ostean zegozen. Gehienik be gau ilunetan argitasun bat bialtzen eben zerura, batez be Bilbo aldeko gorritasun ha, Laba Garaiena ei zena. Niretzat «mundua» Zornotza zen, haragoko hiri ezkutu guztiak biltzen ebazena, non trenak, autoak, hegazkinak eta untziak alkar harrapatu ezinik zebizen, non jentea arin, moltzoan eta koloretsu zebilen, non erdera unibertso inperiala zen.

Eremu badaezpadako baina ikusgarri (eta begiz beteriko) haretara jasten nintzenean, ikusmina eta bildurra eskutik zebizen nigan, geltokietan, kaleak zeharkatzen, batzutan maleta handia bizkarrean, dendetan huskeriak erosiz eta danari irrikaz eta errezeloz begiratuz. Zornotzatik Torrebururantz ninoala, Autzaganeko aldatsaren erdi aldetik gora, eremu magnetikotik libraturik lez nasaitzen nintzen, barriro neure altueran, eta, atzera begira Zornotza oinetan ikustean, gailen sentitzen nintzen. Etxera heldutakoan, lo bat nahikoa izango neban, barriro Zornotza urrunaren iman arriskutsuaz artegatzeko. Mundua zeritxona behean, barrenean nekusala hazi nintzen eta ikuskera hori ezin dot aldatu, munduan bertan nabilela be. Kalean bizi izan nazenean, nire bizilekua beti goitik behera ikusi izan dot. Portuan eta marinel hazi danak mundua parean eta eskueran ikusiko dauela begitantzen jat. Ez dakit. Nirea behintzat, eta menditar ororena beharbada, goitik beherakoa da, bizitza guztia beherago baitabil. Gorago lainoak eta izarrak bakarrik dagoz, baina honeik ez dabe asko laguntzen.



Altuerak alde batetik harrotasun posizional bat erants daike, azpirago dagoen guztia erdeinatzera tentatuz, baina goitik beherakoak behetik gorakoa aldean dauka. Ez da egoera segurra, beti jasteko-jausteko arriskuan baitzagoz, eta orduan igotea, hots, barriro norbere kotara itzultzea, asko kostatzen da, bai gorputzez, bai sentimenez. Baleiteke mundua parean ikusten dauenak bildur eta antsia gitxiago jasatea edo behintzat bere buruaz fidatuago ibiltea munduan. Goitarren abantaila bat izan daiteke beti daukela, preminazko izan ezkero, munduari ihes egiteko norabide bat, kalekumeek beharbada sentitu ezin dabena, mendia mundua baino arrotzago baijake. Honeik eta beste sentipen sare amaibage eta kurutzatu guztia biltzen dau MENDITIK MUNDURA izenburuak. Inoz esan izan dauste liburuaren atalik onena izenburua dela eta ez dautset kontra egin, nahizta beste atal batzuk be badagozela uste dodan, guztiz egizkoak, onak ez dakit baina.

## LAUREHUN HERRI, MILA BERTSO BERRI

Nire bertsolari bizitzan izenburu honek arorik interesgarrienetakoa bildu eban. Liburua 1982an argitaratu zen. Bertan hogeta hamabi herritan egindako jaialdietan kantaturiko bertso eta kopla barriak, tokian tokirako jarriak, batu dira. Hona herrien zerrenda, jaialdien ordenaren arabera: Lea Ibarra (Aulesti), Hernani, Zumaia,

Elorrio, Lekeitio, Gipuzkoako Goiherri (Lazkao), Busturia, Durango, Bilbo-Deustu, Gernikako bonbaketa (Gernika), Beasain, Urnieta, Arrasate, Bolibar, Donostia, Tolosa, Zeanuri, Larrauri, Lauroeta, Urretxu, Amara Berri, Fika, Bedia, Berriatua, Bergara, Añorga, Arriandi, Larrabetzu, Ezozi, Elizondo, Hondarribia, Zizurkil, Izurtza. Liburuan Abadiño be badator bertso sorta bategaz, baina hor ez zen jaialdirik izan. Beste batek kantatzeko egin nebazela uste dot. Beste leku batzutan be egin genduzen jaialdiak, baina ez datoz zerrendan, hareitarako berariaz prestaturiko materialik egon ez zelako. Liburuak sasoi haretako gai orokorragoak be batzen dauz, herri ezbardinetan kantatzen genduzenak, *halan Lemoiz, Tejero, Mendian gora haritza, San Ferminak, Tantum ergo*, kopla sortak eta abar.

Lehenengo jaialdia 1978ko irailaren 24an izan zen, Lea Ibarrako Aulestin. Azkenengoa 1981eko irailaren 13an, Izurtzako pilotalekuan. Hiru urteko bolada izan zen, beraz. Aurretik bertso jarrien arloari sarritan ekina nintzelarik, sen batek zinostan oso lan polita eta eskergarria izan zeitekeela tradizino horreri musika eta guztiko jarraipena emotea. Bazen zenbait grabazino, baina nik zuzenean eta bertso barrien gaia zen herriaren beraren aurrean kantatu gura neban. Gontzal Mendibilegaz berba egin neban eta asmoa ondo iruditu jakon. Halan, jaialdi berean, hak bere taldeagaz bere kontzertua emongo eban eta ondoren niri lagunduko eusten bertso barriak kantatzen. Horrez ganera Lopategik eta Azpillagak be parte hartuko eben, bat-bateko saioa eginez. Kantaldi, bertso barri eta bat bateko saio, jaialdi bariatua eta bistosoa zen, beraz. Gontzalen taldeagaz bertso doinuak entseiatzen hasi nintzen eta gure ilusinoak arestian aitatu datan plazaratu ziren, Aulestiko pilotalekuan. Entzuleek oso arretaz eta ezuste handiz hartu eben, bertako barriak, inork itxaroten ez ebazenak kantatu bainebazen.

Sarreran eta tarteko iruzkinetan, zenbait fantasia mintzatu be jaulki neban, Lea Ibarraren sorreraz eta abarrez. Orain ez daukat zehatz gogoan, baina, itsasoa Oiz mendira heltzen zene-



tik hasi eta badakit aker erraldoiren bat (Lekeitioko «islako akerra») izan zela Lea Ibarrari bere forma sakona emon eutsona, goldea adarretan trabaturik, Oizko izu batetik ihesi zihoala. Datu egizkoz eta alegizkoz nahastutako kondaira ha jentearen gogoan geratu zen eta oraintxe be badira gogoratzen daustenak: «Hi! Zelan ixen zuan harako Lea eta Oizen ipuin zelebre ha?». Lehenengo egunak biribil urten euskun. Usurbildar bat zer nobedade modu izan zeitekeen ikustera hurbildua zen, gustatu jakon, eta atoan deitu eustan, Hernanialdean gauza bardintsua egitea proposatuz. Galarreta pilotalekuan izan zen eta egundoko ezustea emon genduen han be. Abiatze hobarik ez zeitekeen izan.

Ez, ostera, kosta barik! Gogoan daukadaz Aulestiko saio aurreko orduak. «Mendian gora haritza» izeneko bertso sorta estraina hatarako pentsatua neukan, baina eguna ganera etorri ez ezik, aurrera zihoala, ondino amaitzeke zegoen eta ikutuak behar ebazen. Eguerdi ostean, EGINeko lan eguna amaiturik, Bilbotik Aulestirantz ninoan, Larrabatzu-Morga-Gernika bidea harturik. Morgan behera, barreneko errekondoan gora baztartu nintzen, ea urgentziazko azken buru-apurtzeak sorta hornitzen eban. Ez zen, noski, nahitaezkoa, entzuleak ez baiteban nire asmo huts egina igarri beharrik, baina doinua entseiatua geunkan eta batez be nire burmuinak ezin eban jasan ezinera makurtzerik. Ez behintzat hamalaugarren ahalegin oroahaltsua probatzeke. Jaialdia seiretanedo izango zen eta pare bat ordu aurretik iristea derrigorra zen, antolakuntzaren ardura guztia neure gain baitzegoen. Hiru t'erdiak ziren, bide baztarra hartu nebanean, eta lauretan beluen abiatu beharra zegoen. Ez neban lortu lana amaitzerik, baina ez neban etsi, bidean denpora banebala-ta.

Aulestira helduta, pare bat bertso ondino airean zegozen. Batari deitu, besteagaz berba, mikrofonoak probatu, entsegu txiki bat egin, behar ziren oharrak zabaldu eta jaso, ondora eten barik hurreratzen zirenei kaixoak eta ezetako balio ez daben kontuak esan, eta nire burmuina bertsoak biribiltzeko teman zebilen. Egi-

teko prestakuntzak eginak ziren, jentea sartzen ari zen, taldekideei apur baten bakarrik izteko eskatu neutsen, zetako zen azaldu barik, eta oholtzaren eta frontisaren arteko bitarte disimulatu batean harrapatu nebazen azken bost edo hamar minutuetan lortu neban sorta menperatzea. Estutu ezkero, nonondik urten egin behar! Amaituaren poz garaileak falta ziren orraztuen soluzinoak atoan ekarri ebazen eta han kantatu nebana bertsino definitiboaren ia bardin-bardina izan zela uste dot.

Hau eta beste hamaika gauza ezerezean geldituko ziren, derrigorrean izan ez balira, edo halan hartu ez banitu. Derrigor totala hil arte bizitzea dela emonik, ganerako derrigorrak, areago sormenean, norberak hatakotzat sentitzen dituenak direla uste dot. Edo, zuzenago esanda, norbere burua derrigorrean sartzen denetakoak. Zeure asmo bateri edo inoren eskari bateri baietz esatea ez da derrigorra, baina, behin konpromisoa hartutakoan, betetzeaz beste erremediorik ez daukazu eta horixe izan da nire gauza asko eginazo dituen sistema. Abiatu eta gero, nahitaez bururatu behar, etsiaren arrangurara ez makurtzeagatik. Segun nondik begitzen jakon, jokaera hori anbizinotzat edo koldarkeriatzat jo daiteke.

Jaialdien edukia aldatuz joan zen. Lehenengo hogeikoan, batez be dozenaren batean, nire repertorio guztia herri hatarakoxe berariaz jarria zen. Gero edonon kantetako sorta orokorragoak eta, beraz, errepikagarriak sartzen hasi nintzen. Lehenengo hogei horreitan, hogeta hamabostetik berrogeta hamabostera inguruko (inoz hirurogeitik gora be bai) bertso kopurua dago. Batez beste, berrogeta bost bertsotik gora jaialdiko. Amore emotea kostatu jatan, baina azkenean lan handiegia zela ikusi neban, irabazten nebanerako. «Irabazi!». Berba gordinak urten dau, baina egia da. Langintza hareri pozik jarraituko neutson, hatarako behar zen denpora guztiaren ordain minimo bat posible ikusi baneu, baina hori ez zegoen amesterik, orduan antolatzen ginen moduan behintzat. Musikariak, beste bertsolari biak eta neu, eta soinu ekipoa, azkenean baginen hamar bat laguneko taldea eta jaialdiko zen-



bat kobratuko genduen, ba? Kopuruak ez daukadaz gogoan, baina dana ehunda hogeta bost mila pezeta zela uste dot. Nirea orduko bertso saio batena baino zeozer gehiago izango zen. Horregaz egin behar nebazen: jaialdiko eguna bera, beste egun bat, zegokon herrira informazino bila joaten nintzena, gero hori guztia ordenatu eta berrogeta bostetik gora bertso jarri, ondoren zinta mordo bat etara eta herri edo eskualde haretara zabaldu. Eta entseguak eta antolakuntzak eskatzen ebazen jonetorri guztiak eta beste hamaika bitarteko ezuste. Orainetik begituta, pozez harritzen naz zelan eutsi geuntson hainbeste denporan martxa ruinoso baina ilusinozko hareri, eta ez zen gaztaroko zoroaldi geraka bat, denporaldi ha berrogei urte eginda amaitu neban-da.

Materiala osotzeko prozesua honakoa zen. Deitzen eusten herrian, deia jaso eta ahalik arinen, bilera bat egingo neban hango taldetxo bategaz. Horretarako deitzaileari nire asmoa eta metodoa azalduko neutson deian bertan eta haren edo harek emondako kontaktu baten bitartez, bost-sei laguneko talde informatzailea osotuko zen, gitxi gorabehera zelako jentea gura neban ondo azaldurik. Gehienean antolatzaileak eurak ziren. Izentaturiko egun eta orduan batuko ginen eta, batzutan mahai hutsean, beste batzutan afari lege baten inguruan, herri eta inguru haretako barri interesgarriak jasoko nebazen. Normalean informatzaile egitekoek ez zeuken zer emon zeikien ideia handirik, baina nik banenkien zer behar neban eta nahikoa errez etaraten nebazen era askotako gaiak: gertaera barri samarrak, istorioak, pertsonaiak, herrian eta inguruan pilpilean ziren arazoak, herrien edo auzoen ezaugarri historikoak, mitikoak eta abar. Garai haretan, esaterako, kale, etorbide eta enparantzen izen frankistak toki askotan oraindik ikutzeko zegozen. Atal horrek oso gai beroa emoten eban, bai politikoki esanguratsua zelako, bai entzuleen algararako helduleku zorrotzak zekarzelako.

Jasoten neban informazinoak, beti be, bertsoak jarteko modukoak izan behar eban, ez hitzaldi edo artikulu diskurtsibo

bat osotzeko. Horretarako, informatzaileak alkarrizketan bertan maiz zuzendu behar izaten nebazen, zelako datu klaseak izan behar eben argituz. Ez zen beti erreza izaten informatzaileari garrantzizko iruditzen jakozen arazoak bertso jarrien egokitasunagaz buztartzea. Konponbiderik praktikoena zen jenteari lasai berbetan iztea, ostantzean ez baineban neuk nahi nebanik etarako, eta dana jaso, gero behar zena iragazteko. Badaezpada, bileraren amaian beti saiatuko nintzen argi izten neroazen kontu guztiak ezingo zirela bertsotan kantatu eta inork ez zegiala horregaitik desengainurik har. Normalean biltzen zen jente mota bertsozalea edo hurrekoa izanik, aisa ulertzen eben hori. Gero beti aurkitzen neban moduren bat, aitamen soil baten bitartez bazen be, jasotako informazino ia guztia kantuan sartzeko, eta informatzaileak eurak ziren gehien harrituak, emondako barri inkonexo hareik guztiek gero jaialdian zelako forma hartu eben ikusirik. Esan beharrik ez dago jaialdira ezelako antezedente barik zetozen entzuleak sarritan guztiz zurturik gelditzen zirela, herbeste urruneko baten ahotik hain barri lokalak eta zehatzak entzunez. «Baina horrek nola zazkik gauza horiek guztiak?».

Bigarren lan handia koadernoko zirriborroan neroan nahas-mahasa ordenatzea eta sailkatzea zen, sorta batean eta bestean alkarregaz joan zeitekezaen gaiekin kondaira zelanbait lotua osotuz. Handi-handika hori egin ondoren, beharrik handiena beti be ha dana bertsotan jartea izango zen. Nahikoa errez moldatzen nintzen, baina behar handia zen, denpora be luze samarra behar eban. Errez moldatzearen esplikazino nagusia da gaia emonda zetorrela. Nik ez neukan gidoiari bertso forma emotea besterik, ahalik eta erarik interesgarrienean. Gatxena, nire kasuan behintzat, gaia norbere baitatik etaratea da. «Badok hamaika gai» pentsa daikezu, baina lehenbizi gaiak norbera hunkitu behar dau, edo, gai topiko samarra bada, hatara atxikitzeko moduko trataera bat aurkitu behar da, edo gai barria eta originala izan behar dau, eta horreik danok ez dira egunero gertatzen. Hitz batez, dana nor-



bere baitatik denean, edukia eta forma bat-batera doaz eta norbera da dana indarrez sentitu behar dauena, zerbaiti buruz bertsoak jarteko erronkan abiatzeko. Herriz herriko bolada haretan, hamabost egunen epean dana egin behar izaten neban, baina ha nire lan gehigarri bat besterik ez zen, asteko beste guztiez ganerakoa. Behin gaien sailkapena egindakoan, baziren egunak, hatara jarrita, hogeta hamar bertsotik gora osotzen nebazenak. Hori ez dago norbere gaitik etaratako bertsoakaz egiterik. Adibide bat ipinteko, «Mendian gora haritza» sortako sei bertsoak Lazkaoko jaialdiko berrogeta hamazortziak baino gehiago kosta izango jatazen.

Tokian tokiko gaiakaz, gehienak oso aktualak bestalde, hiru bide dagoz, huts egiteko. Gehiago be izango dira, baina neuk gogoan daukadazen hiru kexuetatik etaratako sintesia da. Bata aitamen mingarria da. Oso arretaz eta zorroztasunik handienez ibili behar da, batez be izenakaz eta datu pertsonalakaz. Ez da nahikoa dagokona bera ez mintzea. Nahizta berari ez ardura, entzulea mindu daiteke, gusto txarreko aitamena izan delako. Honetan gogoan dot udaltzain batena. Herrian oso popularra eta maitea zen, mundu guztiak ezizen batez ezagutzen eban eta halantxe kontatu eusten. Honelakoetan erabateko ziurtasunez jokatzen baineban, behin eta barriro galdetu neban:

—Berak onartzen al dau ezizen hori?

—Jakina! Herrian ez dauka beste izenik.

—Ez al jako txarto begitanduko?

—Bai zera! Egunero besterik ez dau entzuten.

—Segur?

—Guztiz! Kanta lasai ezizena, izena esanda, inork ez dau ezagutuko-ta.

Halantxe egin neban eta entzuleei egundoko grazia egin eutsen. Gero, ostera, handik denporagarrenera, pertsonaiagaz beragaz berba egiteko aukera izan neban eta ondo beharrez esan

neutson:

—Zuri buruzko bertsoak oso txalotuak izan ziren. Herriak «Urlia» udaltzaina ez da, antza, nahinor.

«Urlia»-ren lekuan bere ezizena esan neutson eta zapla jaulki eban:

—Entzun nuan, bai, zerbait. Izen hori ez det batere gogoko!

—Ah, ez? Bileran ziran guztiek ziurtasun osoa emon eusten, ba!

—Oker esan zizuten. Sekula ez det izan eta ez det izango.

Ez zen prekauzinorik hartu barik ibilia nintzelako, baina kasu haretan informatzaileek euren okerra niri pasatu eusten.

Huts egiteko beste modu mingarri bat omisinoa da. Elorrion gertatu jatana, esaterako. Orduan ospe betean zegoen «Jolasleku» izeneko dantzaleku handi eta elegantean izan zen jaialdia, egundoko arrakastaz. Geuretzat be ezuste itzela izan zen. Bertso sorta batean auzoak banan-banan aitatzen eta bakotxaren ezaugarriak kantatzen nebazen. Handik denporagarrenera, elorriotar batzukaz kafetegi batean topo egin neban eta, jaialdiaren gomuta pozgarria ondino barri-barri neukala, esan neutsen:

—Neure bertsolari bizitzako pozik haundijenetakue Elorrijjoko Jolaslekutik etara neban!

—Bai! —urten eban emakume batek zorrotz —. Politxa ixan zan, baiña gure auzua etzenduan aitxatu!

—Ezetz? Zein dde, ba, zuen auzue?

—Aldape.

—Oh! Ba, niri ez ostien ixen hori esan.

—Hantxe dao, ba! Da geu be hantxe gauaz, munduko lekurik maitxagarrijjenian.

—Parkatu biko'stazue, baiñe nik elorrijjotarrek eurek emoniko informaziñotik kanteu neuen.



Auzoak edo antzeko zerrendak zirenean, aparteko ardura behar zen, inor ez kanpoan izteko. Deskuido posibleen barri sobera banekienez, arretarik zorrotzenez ibilten nintzen, behin eta barriro omisinoen arriskua adierazoz, baina Elorrioko kasuan informatzaileak eurak deskuidatu ziren. Hutsegitea errezago izan zeitekeela somatzen neban ataletan (tabernak esaterako) ez nintzen sartzen. Norberak hartu behar dautso aurrea informatzaileen huts inboluntarioari.

Hirugarren akatsa informazino okerra da. Ez daukat ahazteko Hernaniko Galarretako jaialdiko hutsegite batek zelako ondorioa ekarri eustan. Orduan ondino Lasarte ez zen udalerri. Beste zenbait gauzaren artean «Lasarteko hipodromoa» kantatu neban, urrunekoek horixe entzuten baikenduen. Usurbilen egindako aurreko informazino bileran be «Lasarteko hipodromoa» esan eusten eta nik halantxe kantatu neban. Ondorengo egunetan, bai etxera deietan, bai EGINen, ez neban erretolika gozoa jaso. Neuk be EGINen idazten baineban, parkamena eskatu neban, okerra zelan gertatu zen azalduz. Usurbilen ez dakiena edo konturatzen ez direna Bizkaiko puntatik nekez zuzen neikeen. Auzia ez zen horretan amaitu. Bizpairu urte igaroak izango ziren, Zubietako bertso saio batera deitu eustenean. Gauean, jaialdi aurretxoan, han gengozen plaza ondoko tabernan, zeozer jan-edanez, hasteko aginduaren zain. Aranalde genduen gai jartzaile. Hatan, badatort Zubietako batzordeko bat eta dinost:

—Pentsatu dugu saioaren haseran zuk bertso batzuk kantatzea, hipodromoaren nongotasunari buruz Galarretan egin zenuen okerra zuzentzeko.

—Aizu, nik bere garaian eskatu nuen barkamena eta eman beharreko argitasun guztiak eman nituen.

—Guretzat auzi garrantzitsua da eta herriaren aurrean ere egin behar duzu.

—Baina nola hasiko naiz duela bizpairu urteko oker bat, inork gogoan ez daukana, jaialdi batean zuzentzen, bertsotan gainera?

—Egin beharra daukazu.

—Esplika ezazu zerorrek gaia hirulau hitzetan eta ni gertu nago bertso bat edo bi ondoren kantatzeko.

—Ez! Zeuk egin zenuen okerra eta zeuk zuzendu behar duzu.

Etxera ospa egiteko adorerik izan ez nebanez, trantzea irunsteaz beste erremediorik ez jatan gelditu. Aranalderi esan neutson: «Esan itzak mesedez hitz batzuk aurretik, jendearen arreta apur bat zentratzeko eta gero nik pare bat bertso kantatuko ditiat». Horixe egin eban hak eta halantxe bete neban ezarri eusten obligazino apalgarria. Ikasi neban, bai, nongoa zen «Lasarteko Hipodromoa».

Hiru anekdota honeiz besterik ez daukat gogoan ehunka izen, ezizen, pertsonaia, toki eta gertakari aitatu neban ibilera arriskutsu haretatik. Beharbada beste oker edo alusino mingarri batzuk be izango ziren, baina nire belarrira ez ziren heldu. Ez dot uste maila horretan huts handirik egin nebanik. Beste kontu bat da maila politikoan edo herriko zenbait arazo garrantzitsuren aurrean norbaitzuk hasarratzea, batez be saiora etorri ez zirenak edo berariaz satirizatzen nebazen izen publikoak, politikariak batik-bat. Maila horretako minen erantzupena asumiturik neukan. Oso gitxitan gertatuko zen nik kantatuaz min hartzeko moduko jenterik entzule egotea. Durangoko jaialdian, harrobi baten izena zirikatu nebanean, gizon bat tentetzen eta alde egiten ikusi neban. Harrobiaren ugazaba izan ei zen. Ez daukat beste halako kasurik gogoan. Gehienean entzule guztiek bat egiten eben bertsoen gaiekin eta trataerekin eta zenbat eta zorrotzago jo, hainbat gustorago entzuten eben.

## JAIALDIEN EBOLUZINOA

Hasierako jaialdi mistoetan, kantaldia eta bertsoak izaten ziren. Gontzal Mendibilek bere taldeagaz hiru bat ordu laureneko eki-



taldia, erdian Lopategi eta Azpillagaren bat-bateko saioa eta ondoren nik musikariakaz bertso jarriak. Ez dakit ordena beti horrela eroaten genduen, baina hor nonbait. Laster ikusi zen kanta entzuleak eta bertsozaleak ez zirela entzuleria bera, guk aurretik uste lez. Oro har, guregana batuko zen entzulerian kantazaleak bertsozale eta bertsozaleak kantazale izango zirelako ustea egizkoa zen, baina ez intentsitate bardinean, jaialdi mota haretan behintzat. Gehienek bertsoaren aurrean beroago erantzuten eben eta kantaldia apur bat desplazaturik geratzen zen. Musikari batzuk behar nebazen ezkero, nire asmoa zen bide batez, laguntzaile soilak izan beharrean, euren saioan be luzitu zeitezen eta halantxe gertatuko zela itxaroten genduen, baina laster ikusi zen zati bien artean desoreka bat sortzen zela, kantaldiaren kalterako. Jaialdiaren egitura aldatu beharra zegoen. Argi zegoen denpora guztia bertsoen inguruan bete behar zela. Ez dakit zenbat jaialdiren ondoren, Gontzalen taldetik banatzea erabagi genduen. Oso lagun eta pozik, baina ez geuntson etorkizunik ikusten. Hareik euren saioa ez egitekotan, nik be ezin nebazen taldeko musikariak erabili, konpromiso kurutzatuak gertatzen baitziren. Penaz, bakotxak bere aldetik jarraitzea erabagi genduen.

Orduan, ez dakit nork arrastoa emonda, Josu Zabalagaz bat egin neban. Gernikan zegoen maisu eta gogoan daukat, asmoa azaldu neutsonean, zelako baikortasunez hartu eban. Josu Zabalagaz topo egitea niretzat oso ebazgarri izan zen, bai bere ideia musikalakaitik, bai berak jarten eban gogoagaitik. Josuk akordeoia joten eban eta gitarra bat behar genduen. Eta horregaz planto. Jaialdia sinpletu egin behar zen. Bertso usainean zetorren entzuleak musikagaz asko eskertzen eban, baina ez zegoen lar konplikatu beharrik. Akordeoiak eta gitarrak sobera horni zeikezen eskakizun musikalak. Josu Zabalak baeban lagun gitarra jole bat, honek onartu eban, entseiatzen hasi ginen eta aurrera. Gitarra jole aragoitarrak ez zekien euskeraz eta hori oztopo handia gertatzen zen, bai bertso mundua behar zen estiloz jarraitzeko, bai

herrietako ibileretan, oso gogor egiten baijatan gure artean erderaz aritu beharra euskaldunen aurrean. Denpora laburraren buruan bizilekua aldatu eta urrundu behar izan eban eta hortxe amaitu ziren haregazko lanak. Orduan IZ-ko Fernando Unsainegaz harremon handi samarra neukan eta gitarra lana bere gain hartu eban. Honeikaz biokaz azkenerarte jarraituko neban, tartean Tito dultzaina joleak, Irizar pianojoleak eta Juan Mari Beltran tresna anitz joleak be (ez dakit inor ahaztu jatan) bolada bana egin ebelarik; Lopategik eta Azpillagak egiten eben bat-bateko saioa kenduta, Lopategi bakarrik geratu zen taldean, bai garaiko gertaerei buruz edo bere zenbait bertso tarteka kantatzeko, bai nik jarritako kopla sortak txandaka kantatzen laguntzeko. Horrela taldea txikitu eta jaialdia merketu egin zen.

Jaialdiaren barruan aldakuntzarik handiena entzuleak hain maitea dauen eta musikari hain ondo datorkon koplaritza sartzea izan zen. Batez be leku bakotxean jasoten nebazen barri umorezkoak eta ironiaz tratatzeko modukoak bertsoz baino gozoago sartzen ziren koplaz. Bertsoa eta kopla bereizten jakin ezkero, noski! Azken urteotan koplaritzaren zentzuna berreskuratzen bagoaz be, bertsolari pentsakerak triskantzak egin ditu koplaritzan, larogei erraldeko zezena teilatuan pasiatzen lez. Jenero biak hurbilak izan arren, diferentzia handiak daukez eta horrei eustea da aberastasuna. Kopla tradizinoaren bizipenik eta sentierarik ez daukan bertsolaritza koplagintzan sartu denean, bertsoak egin ditu, kopla doinuei aplikaturik. Luzeraz koplak laburragoak dira; baina horrek ez dau ezelan be esan gura kopla bat bertsoaren erdia denik, hogei urteko gaztetasuna berrogeikoaren erdia ez den lez. Koplak errepika edo, zelanbait esateko, garapen itzulkaria behar dau. Horixe da grazia aparta emoten dautson elementuetariko bat. Bestalde, laburra izanik, koplan ez dago betelanik. Areago ondino, gauzak espazio txikian esan behar diren ezkero, lotura gramatikalak eta diskurtsiboak ezabatu egiten dira, beste logika mota bat sortu dela pentsarazoteraino. Eta sarritan egia da, baina



sakoneko logika baino gehiago da adierazoteko modua. Alkarregaz zerikusi itxurazkorik ez daben ideiak alkarren ondoan ipintean, efektu berezia sortzen da. Koplaritza gehiago da bisuala logikoa baino. Egoerak edo elementuak alkarren ondoan jarten dautsuz eta zeuk aurkitu behar dozu lotura. Eta loturak era askotakoak izan daitekezen ezkero, anbiguetate anizkor bat izten dautsu, zalantzaren lilura, ahalbide ezbardinen hautamena.

*Mendi altuen edurre*
*bota surtera egurre*
*alaba galanten amak*
*mutil zantarren bildurre.*

Mendiko edurraren eta surtako egurraren erlazinoa berehala jasoten da, baina zer zerikusi dauke amaren bildur horregaz? Zerikusirik naturalena, naturaren zentzun osoan. Koplaren ingurunea rurala izanik, hotzari kontra egiteko sua egurrez kargatzen dauen amak suteko leihotik bistan dauka mendiko edurra eta haren pentsamentua bere lanaren eta natura inguratzailearen barruan gertatzen da. Baserriko biziera eta bizilekua ezagutzen dituenarentzat, asoziazinorik naturalenak dagoz hor. Logika nabaria da, elementuen loturarik behar ez dauena. Interpretazino bat da hau. Baina izan daiteke edurrak sua eskatzen dauela eta suak maitasunaren garra gogoratzen dauela eta ama, gazte sasoian bizi izan eban esperientziaren arabera, orain alaba ederra mutil zantarrak eroango dautson bildur izatea, eta abar eta abar.

Pintore baten koadruan emakume pentsakor bat surtara egurra botaten ikusiko bagendu, mendi altuko edurra bistan dela eta angelu batean alaba edarra mutil bategaz agiri dela, zelan interpretatu beharko geunke? Nahikoa erlazino nabariak dagozela emonik, batek holan eta bestek halan ulertuko geunke, baina beti be begien gozamenean, egoera ezbardinak hurbiltasun espazialaz eta bakotxaren sentimenaz beste lotura barik kontenplatzean. Bistan dagoena ez dago esplikatu beharrik, gehienik inter-

pretatu baino. Bisualtasuna desagertzean, loturak diskurtsiboki azaldu behar dira, ideiak alkarregaz batu daitezen, eta horixe da logika kontzeptualak egiten dauena, ez logikoago delako, beste logika mota bat delako baino. Koplen logika bisualago da. Alde horretatik plastikoago da, baina bestetik abstraktuago, loturak ezabatzen baititu. Abstrakzino bisuala.

Kopla guztiak ez dira, jakina, estilo horretakoak, batez be kopla txikiak edo porrusaldakoak. Honeitan be lotura sintaktikoak gehienean ezabatu egingo dira, baina ideiak edo egoerak iustaposizino soilez, edo paralelismoz, edo metaforaz, edo sarritan kontrastez erlazionatzen dira. Eta danetan kantuan berbak biraka errepikatuz joateak inpresino aldi berean ingurakorra eta anizkoitza areagotu egiten dau. Bertsolarien pentsakera diskurtsiboari, edo umorearen zirizko identifikazinoari, errepika «alperreko» horreik edukiz betetzeko tentazinoa datorko, nahizta gero ustezko edukia luzapen merkea gertatu. Arrazoiak josi egin nahi dauz, baina funtsean loturak erantsi eta betelanez kargatu besterik ez dau egiten. Arestiko kopla honela osotu daiteke zortziko handi batean:

*Leihotik zuri han agiri da*
*mendi altuan edurra*
*etxea hotzak jango ez badau*
*bota surtara egurra.*
*Ardura batek sakondu dautso*
*bekokiaren zimurra*
*alaba eder galanten amak*
*mutil zantarren bildurra.*

Bertso hau ez da txarra, baina koplaren sintesi argia alperrik puztu eta bere adierazkortasun anizkotxa mugatu egin dau. Ahapaldi eder bat hondatu besterik ez dogu egin. Bertsolaritza koplaritza baino askoz esplikatzaileago da, edo, alderantziz esanda, koplaren laburtasunak ez dau esplikazinoetarako tokirik emoten. Elipsi handiak egin behar ditu, bai sintasian, bai ideien lotu-



ran, eta horrela estetika ezbardina sortzen dau. Bertsolariak, batetik ideia lokabeakaz jokatzen ez dakielako, eta bestetik ustez esateko gehiago aportatu gura dauelako, errepikak testuz ordezkatzen ditu, lau puntuko eta gehiagoko «koplak» egiteraino. Estilo bat eta jenero bat izorratu dogu.

Nik kopla tradizinoa bertsoarena baino lehenago jaso neban etxean eta inguruan eta beharbada lehentasun afektibo horrek balorapen larregizkoa daragist, baina saiatzen naz jenero biak objektiboki epaitzen eta maitatzen. Koplaritza jaialdietan sartu nebanetik, saioak beste kolore bat hartu eban. Behin bertso sortak, behin kopla sortak, bakotxa bere estiloan jenero biak konbinatuz, entzunkizun biziago eta maitagarriagoak urteten eban. Dana da, noski, gustuen araberakoa eta ni koplaritzak xarmatzen nau, baina, gustuak gustu, behar dena da jenero bakotxak bere estiloari eustea, hartzaile bakotxaren gustuak zegaz gozatu euki dagian. Koplaritza bertsolaritzak iruntsia izateaz ez dogu ezer irabazten. Bertsolaritzak tarteka koplaritzaren zenbait elementu beragantzeaz, ostera, asko irabaziko leuke.

Hiru urteko bolada interesgarri haretan, jaialdiek korritu ahala, tokian tokiko gaiak gitxituz eta gai orokorrak gehituz joan nintzen eta gehienean gai lokalak koplatan emoten nebazen. Gai orokorrak be pilatuz zihoazen eta halan, egun-eguneko eta tokitokiko sorta batzuz beste guztia ondo betetzeko materiala sobera neukan. Gai orokorretan gehienak aktualitate handikoak ziren, halan Lemoiz, Tejero, Atletic txapeldun, Iparragirreren mendeurrena, Reala txapeldun, Gernikako bonbaketaren oroimeneko ospakizunak, espetxeko bizitza (hau beti aktuala zoritxarrez) eta abar. Beste gai batzuk, batez be kopletakoak, intenporalagoak ziren, baina ez horregaitik gitxiago interesgarriak, *Mendian gora haritza, Apaizak eta neskazaharrak,* eta antzekoak lez. Egun-eguneko gaiak eta herriko bertakoak Lopategik erdi bat-batean, edo egun batzuk aurrerago jarrietan, edo egunean bertan biok batera tarte batean, edo kopla sorta batean sartuko genduzen. Gai inten-

poralak, aktual orokorrak eta eguneko-tokikoak konbinatzeko eta asko zegoen, beti be zer diferentearen itxura emonez, nahizta jaialdiaren egitura nagusia egina geunkan. Horrek hainbeste informazino jaso eta hainbeste bertso jarri beharraren lana gitxitzen eban. Eguneko eta tokiko gaien barri egunean bertan jasota be aisa sar zeitekeen emonaldian. Beste batzutan, prestakuntza gehiago beharreko gai delikaturen bat baldin bazegoen, (Zizurkilen, esaterako, Joseba Arregi torturaz hil ebenekoa) pare bat egun lehenago jabetzea nahikoa zen.

Hiru urtegarrenean ekitaldi mota ha amaitzea erabagi genduen. Motibo zehatz guztiak ez daukadaz gogoan, baina neu izango nintzen erabagitzaile nagusia. Ibilera zaila zen, nekosoa, ardurak guztiak neure gain ziren eta ez neban errezteko eta arintzeko modurik ikusten. Taldekideak alkarrengandik urrunekoak ginen eta bakotxa bere lan eta langintza oso ezbardinetan sarturik genbizen. Oso gatxa zen nik ezinbestekotzat joten neban prestakuntza eta disziplina minimo bat eroatea. Sarritan entseguak jaialdi egunerako bertarako izten genduzen eta azkenean hagaitik edo horregaitik (ordurik errespetatu ez genduelako, martxan beste oztopo batzuk sortzen zirelako, soinu probak egin behar zirelako, baldintza egokirik aurkitu ez genduelako...) erdi inprobisatzen agertzen ginen eskenatokira. Onenean be, sartzen ari zen jenteak beti arrapaladan entseiatzen harrapatzen ginduzen. Horrek zeharo desesperatzen ninduen eta ez neutson ikusten zuzentzeko biderik.

Arrakasta aldetik be, nahizta neuk eskeintza interesgarria zela uste, ez neban ikusten goranzkorik, medioek ez baiteuskuen jaramonik egiten. Baginenik be ez. Bilboko delegazinotik neuk behar egiten neban EGINen be ez ginen esistitzen. Behin lankide batek kontatu eustan zelan Hernaniko egoitza zentraleko kultura saileko buruari esan eutson:

—Amurizaren emanaldi berriari ez al diozue aipamenik egin behar?

—Zer berri zekarrek, ba?



Horixe erantzun ei eban mesprexuz eta hatan amaitu ziren aitamenak. Norbera lankide den medioan tokirik merezi ez dauenak pentsa besteetatik zer itxaron daikeen. Emonaldia gertatzen zen tokiko antolatzaileek zelako zabalpena eta hotsa etaraten eben, horixe zen gure marketing bakarra eta maila horretan autortu behar dot ezin harrera hobea euki genduela herri gehienetan eta entzuleriak, ugari batzeaz ganera, gozamen eta autormen handiz urteten ebala. Maila direktoan arrakasta izan arren, ostera, goragoko esferetan, hots, eritxiaren esfera dominanteetan, arretarik lortzen ez badozu, gatxa da irautea, gizarte honetan behintzat. Ez daukat gogoan hiru urte hareitan inork alkarrizketa bat egin eustanik, ez gure lanaren barririk inon zabaldu zenik, aitatutako maila lokal eta esker oneko horreitan izan ezik. Hemen entzule batzuk esaten hasi jakuzen:

—Jaialdi hau grabatzeko asmorik ez al daukazue?

—Ez diagu pentsatu ere egin —erantzuten nuen—. Oso motibo lokalak eta mugatuak dituk, Euskal Herri mailan zabaltzeko.

—Pena duk, ba!

Erdibide domestiko bat probatzea pentsatu genduen, jaialdiaren ondorengo egunetan inguru hatarako zinta batzuk atareaz. Emonaldia grabatzen zen eta, antolatzaileek zinoen kopuruaren arabera, honenbeste kasete editatzen genduzen, teknikoki rudimentarioak, baina oso merke saltzen zirenak, ia kostu prezioan, antolatzaileei irabazpide txiki bat itzirik. Halantxe banantzen ziren ehun bat zinta, inoz berrehundik gora be bai.

## LANTZEAN MUSTURREKO BAT

Behin edo behin (egia esateko, behin bakarrik gertatu jatan hau) musturreko galanta hartzea tokatu jatan, ikaragarri lan handia

eskatu eustan emonaldi batean ganera. Batzorde antolatzailetik esan eusten egun batzuren buruan ordainduko eustela, udaletxean beharreko gestioak egin ondoren. Jaialdia exitua izan zen. Taldekideei egunean bertan aurreratzen neutsen neure patrikatik bakotxari zegokona, jaialdiaren ordainketa geroago egingo ebela agintzen euskuen lekuetan. Halantxe egin neban dinodan kasuan. Zintak be hurrengo astean eroan neutsezen, berbatutako moduan, berrehun uste dot, honeik be lehenengo neuk ordainduak. Beraz, hogeta hamar bat mila hogerlekori jarein nion, gero hogeta hamabost hartzekotan. Orain hogei urte dirutxoa zen hori eta gaur be dozenerdi ostikada baino hobea. Egunak eta asteak aurrera zihoazen eta inondik ez zetorren ezer. Norbera erreklamatzen hastea, barriz, harturena baino gogorragoa da. Nozean behin, batzordeko baten bategaz topo egiten nebanean, honako animoak entzuten nebazen:

—Ondino udaletxean ez dogu ezer lortu, baina ari gara handik eta hemendik eragiten.

—Zer egingo dautsogu, ba, ordaindu gura ez badabe? Honelako topikoekin erantzuten neban, nahizta gurago izango neukeen entzutea: —Zu trankil! Udaletxetik ez bada, egingo dogu bidea kobratu dagizun.

—Zintena behintzat egizue eta bestea ahal denean izango da —amaitzen neban.

Hirulau hilabete igaroak ziren eta, ondotik pasatzean, antolatzaile baten lantokira sartu nintzenean, hara non erreparatzen dautsedan zinta kaxei, mahaipe batean hautsez beterik, zabaldu be egin barik.

—Zinta honeik zelan dagoz hemen? —hots egin neban tonu garratzean, ikuskizun haren kamusada ezin disimulatuz.

—Ba...

Ez neban entzuten zer atxaki jarten ari zen be, mahaipeko kaxa hautseztatuei inpotentziatik begitzen neutsela. Jaialdia-



ren oste hurbilean interesgarri izan zeitekezen zinta hareik hainbeste denporaren buruan ez zeuken zentzunik. Kaxak hartu eta etxera ekarri nebazen. Ondino han egongo dira ganbara baztarrean tatarrez, saguen nobedade. Saldu bakorik ezin eskatu eta kobratu beharrekorik ezin eskuratu. Gaur arte. Honezkero gatxa izango da udaletxe haretan eta antolakuntza honetan nitaz inor gogoratzea. Egia da hainbeste saioren artean marro bat gertatzea ez dela hondamendia, baina lehendik oso limitean dabilena honelako musturrekoak asko abailtzen dau. Beste antzeko kasu bat handik urte batzutara gertatu jatan, Anje Duhaldegaz nenbilela, baina hemen talde osoak urten eban galtzaile, bakotxari zegokon heinean.

Ez neuk langintza hareri interesik ikusten ez neutsolako edo entzuleek erantzuten ez ebelako, baina ibilera ha bertan behera geratu zen. Handik urtebetera material guztia argitaratzea pentsatu neban eta halantxe etara zen LAUREHUN HERRI, MILA BERTSO BERRI, bolada haren lekukorik eta ondoriorik baliotsuena. Izenburuaren «laurehun herri» liburuan zehar datozen herri izenen gomuta dira. Ez dira, noski, danak herri edo udalerri, baina honeik eta aitatzen diren auzo eta toki izen guztiak jota, larehun bat izango dira. «Mila bertso berri» aurreko zenbakiaren paralelismoan pentsatu neban, bai ugaritasunaren esanahian, bai zenbakiaren zentzun zehatzean, izan be mila baitira, dozena erdi gora behera. Tokian tokiko bertso eta kopletan 831 kontatu dodaz eta orokorretan 172. Tartean izan ziren bidean galduak eta beste batzuk bilduman sartzeko interesik ikusi ez neutsenak.

Liburu honek atsegin handiak emon daustaz. Jaialdien bilakaeran maila batetik gorako medioek albo edo mezprexu egin baeben, danen bildumak, urteen buruan, autormen pozgarri asko ekarri daust, ez hedaera masiboan, baina bai minoria kualitatibo batean. Bertsolaritzan eta literaturan aditua den batek baino gehiagok agertu daust lan honen gorespena, baita miresmena be batzu-

ren kasuan. Dana jota, ez nago kexatzeko moduan nire bertsolaritzako aldirik oparoenetako haretaz.

## KALE SAIO IBILTARIAK

Sasoi haretan hasi eta gaur arte, kale saio ibiltariak oso gogoko izan dodaz, koplaritza eta bertsolaritza pare bat tresnaren laguntzan konbinatuz, batez be trikitia eta dultzaina. Jentea erruz batzen eta hara-hona mogitzen den Ibilaldi, Ihauteri eta antzeko jaietan, gozaldi eder ugari hartuak gara, baita ustez emonak be. Kepa Junkera, Joan Mari Beltran, Jose Ramon Arbe, Aingeru Berguices, Josu Zabala... hainbat musikarigaz egin dodaz horrelako abenturak. Lehenengo urtenaldia Ibilaldi batean izango zen, Getxon uste dot. Kepa Junkera soinu txikiaz, Joan Mari Beltran dultzainaz eta ni piladun altaboz bategaz, hor hasten gara lantzean zirkuitoko baztar batean geure erromeria egiten. Jentea behingoan inguratzen zen, gu be ez baikinen inor bako lekuan hasten, eta egundoko giroa eta emozinoa sortzen zen. Bat-batekotasunak horretarako deabruak daukaz, aurrean daukazuzen entzuleak eta erreakzinoak eurak baitira kantagai. Leku batean, lortutako berotasunaren arabera honenbeste denpora eginda, nahikoa zela pentsatzen genduenean, tibiri-punba, bidekoari heldu eta beste leku batera. Edozein zokotan sor zeitekeen jaialdi txiki bat, sarritan ehundaka lagun aurrean batzen ebazena.

Inor entzutera beharturik ez dagoen eta norberak be ezer egituraturik eskeintzeko obligazinorik ez daukan ekitaldi espontanoetan egoera bitxiak eta ezustekoak gertatzen dira, inprobisazinoari ahalbide amaibakoa emoten dautsoenak. Gauzarik barregarrienak, serioenak, satirikoenak, sentiberenak bat egin daitekez bilakaerarik naturalenean. Unean bertan espontaneoa izateak ez dau esan gura aurretik mentalizatze eta prestakuntza bat behar ez denik. Doinuak eta egoera posible ezbardinetarako patroi batzuk pentsatuak eta entseiatuak behar dira. Oinarri horregaz, egoerak eta norbere aldarteak erabagiko dau jardunaren bilakaera, ikusleari guztiz espontaneoa irudituko jakona. Izan be, halakoxea da hein handi batean, baina ideia eta izpiritu orokorra, behar diren malgutasun guztiak barru, aurrez ondo asimilaturik eroan behar dira.



Getxoko Ibilaldi haretan kostatu jakun entseiatzeko leku egoki bat aurkitzea. Iurretako Arriandin batzeko geratu ginen, hango eskola ondoan entseiu baterako baztar bat errez aurkituko genduelakoan, baina batean errepideko burrundada zela, bestean jentea zebilela bertan, ezin ginen inon kokatu. Geu be, bozgorailu, soinu eta batez be dultzaina zirela bide, nahikoa zaratatsu ginen eta leku bakartia behar genduen. Oromiñon zehar, Munitako mendatean gora hartu genduen eta azkenean, denpora aurrera eta Getxo ondino urrin baitzegoen, Ibarruri aldeko maldaren erdi inguruan, tentsino altuko dorre handi baten azpian egokitu ginen. Errepidetik bistan gengozen eta pasatzen ziren auto batzuk abiadura mantsotzen eben, txokaturik segurrenik batbateko ikuskizun erdi bibliko ia idiliko haretaz. Nik errepideari bizkarra emonda kantatuko neban, baten batek ezagutzeko lotsaz. Beltrani eta Junkerari ez eutsen askorik ardura.

—Bai zera! Iberduero argindarrean hari musikala sartzen ari dela pentsatuko dabe.

—Edo Basozaintzak piztiak baretzera bialdu gaituela.

## TOLOSAKO IHAUTERIAK

Honelako ekitaldirik beharbada esplosiboena eta gogoangarriena Tolosako ihauteri batzuk izan ziren. Josu Zabala eta biok han azaldu ginen mozorroturik gauerdian, Tolosako etorbide nagusi eta jendeztatuan. Behin haraino jo ezkero, ez ginen baztarretik hasiko. Ha sorgin jantzia eta orgatila baten ganean bere akorde-

oiagaz jesarria, eta ni euripeko baserritarra, pare bi prakazaharrez, tuboak hanka batetik tatarrez, zakutzar bat burutik eta bozina-altaboz bat eskuan. Etorbideko jentetzan aurrera, pasaeran begitzen euskuen, baina jaramon handi barik, beste asko be era zelebrean baitzebizen. Halako batean hutsune txiki batean geratu ginen, Josu joten hasi zen eta soinu hotsak inguruko buruak gugana biratu ebazen. Bideko labur baten ondoren, jente pilo handi baten arreta ganean genduela ikusirik, trikiti pieza bat abiatu zen. Aldakuntza normala iruditu jaken, batzuk dantzan hasten zirela. Segundo gitxiren buruan, gordeta neroan altaboza atara eta koplari hasi nintzenean, buru guztiak teink geratu ziren, dantzariak be geldi. Entzuleei eurei zuzenduriko koplek inguruasamaluze jarri eben. Aurpegi ezagunak nekutsan, baina eurek ezin ninduen ezagutu eta zirkunstantzia horrek eta jentearen bat-bateko erreakzinoek kopla zerrenda luzea kantatzeko gaia emon eusten. Igarten neban «nortzuk dituk hauek» alkarri galdetzen eutsoela, baina nahikoa denpora luzean ez eutsoen antzik emoten. Gero, ahotsetik ezagutu ninduenean, misterio bat hautsi bazen, beste misterio batzuk abiatu ziren. Josu Zabala ez zen oraindio hain ezaguna, «Hertzainak» taldearen aurreko kontuak baitira honeik, eta haren sorgintasun misteriotsuak be emon eban gai ugari.

Saio bat amaitutzat emondakoan, orgatilari heltzen neutson eta aurrera egiten genduen, sorginak ganetik soinua joaz. Josu ez zen astunegia, baina bera, soinu, aulki eta orgatila, metro asko ez neban geratu barik egingo. Atsen! Eta barriro kantura, behin koplatan, behin bertsotan. Halako giroan kolaboratzaile ugari sortzen da eta nahi ebanari altaboza izten neutson, horrek gai barriak emoten eustazela. Erdaldun txispatu bat inguratu zen, erderaz kantatuz eta altaboza beretzat hartu guran. Nik euskeraz adarra jo arren, ez eban ezer ulertzen eta, jentearen txaloak beretzakotzat harturik, geroz gehiago harrotzen zen. Azkenean pare bat kopla gaztelaniaz eta argi ulertzeko moduan kantatu neutsozen eta aldendu zen nonora, ostantzean plan guztia izorratu



behar euskun-da. Espontaneo euskaldunak be hurreratzen ziren, bai erretolikan, bai bertsotan, baina honeik, geure saioan hasten ginenean, isildu eta errespetatu egiten ginduezen.

Ez daukat ahazteko Otsailaren 23ko Tejeradaren urteurrena zela hain zuzen, ez nago ziur eguna bera ala bezpera. Kasurako bardin eutson. Baneban Tejerori buruzko bertso sorta bat jarria eta honek eta Milán del Bosch eta ganerakoei bat-batean kantaturiko koplek jentea algaran jarten eben. Etorbidea alde baterantz hirulau geraldi eginez amaitzen zenean, heurt eta alderantzizko norabidean abiatzen ginen eta halantxe gauerdi ingurutik goizeko bostak edo seirak arte. Jente moltzo batek bizpairu ekitalditan atzetik jarraitzen euskun eta izan ziren gaurik gehiena gure aldamenean emon ebenak. Saio batzuk hunkigarriak eta euren sinpletasunean apoteosikoak izan ziren, ehundaka entzule zirela. Izango ziren bostehundik gora laguneko uneak, jentea batzea oso erreza baita, norbera jentetzan sartu ezkero. Gau guztian ikusmiran eta kalean atzera-aurrera ibilteaz beste zereginik ez zeuken gehienek, guri orduerdi bat eskeiniagatik, baeben edozetako astia.

Jai giroan batzen den jentetza batean, gehienak uste baino pasiboago egon ohi dira eta, euren jardun edo antzezpen propioan ari ez badira, desiatzen dagoz zeozer diferentea ikusteko. Ikusmin anbientala kinatzen asmatu ezkero, pasaeran pare bat minuturako ustean geratu denak beharbada orduerdian edo luzaroago jarraituko dautsu, gustatu jakolako, edo beste zeregin urgenterik ez daukalako, edo une haretan ezer pentsatzeari itzita dagoelako. Beste batzuk han dagozela eta norbera be egon. Entzule atxiki bako hau oso publiko ona izaten da kale giroetan. Lantzean koadrila batek zerbait hartzera gonbidatzen ginduzen, baina behin bakarrik lagundu geuntsen tabernara, atseden hartzeko eta eztarriak apur bat deslehortzeko. Gu ez ginen Tolosara joan tabernaz taberna beratzera, geure «kale lana» egitera baino. Espontaneoen setiotik eta tabernarako tentazinotik ondo kontrolatu gen-

duen geure ibilera eta azkenean geuk uste baino gau biribilago urten euskun. Goizean amaitzea erabagi genduenean, nekearen hondakinak ginen, baina bueltan etxerantz genkarren pozak egunsentirantz zetorren eguzkiari ez eutson bekatxik.

## DISKOAK

Gorago aitaturiko MENDITIK MUNDURA liburuaren izenburuari loturik agertu zen nire lehenengo diskoa, neuk bape bilatu bakoa. Nire burutik oraindio ez zen pasatu diskorik grabatzerik, baina Gipuzkoako herri batean, uda jaietako bertso saio baten ondoren, gizaseme bat hurreratu jatan, IZ diskoetxeko Fernando Unsain zela esanez eta bertso disko bat argitaratzea proposatuz. Hirurogeta hmazazpia izango zen. Lehenengotan gabonetan kukua entzunda baino noraezago geratu nintzen. Zelako bertsoak, bat-batekoak, barriak, edo zer izan zeitekeen itaundurik, «neuk gura neban modukoak» erantzun eustan. Okerrago! Askatasun osoagaz lanik gatxena jarten dautsue, hautatzea eta asmatzea be norbere esku geratzen baita. MENDITIK MUNDURA liburuko bertso sortak aitatu neutsozen, lantegi barriei heltzeko nagiz, eta ondo iruditu jakon. Bistan zen hareri lanaren ezaugarriek barik nire baietzak ardura eutsola. Lehenengo harremona pentsatuko nebala agindurik amaitu zen. Etxeranzkoan, neure «Dyane»an eta goizaldean, lainoak eta iretargia eta haragoko izar jareinak alkarren kontrako norabidean nor lasterrago zihoazen eta ezeinek ez eban haintzat hartu, ea zelan ikusten ninduen diskogile. Hurrengo harremonean baietz erantzun neban eta, behar ziren prestakuntzak eginik, astebetean Bartzelonako estudio batera eroan ninduen grabatzera.

Niretzat nobatada handia izan zen ha. Alde batetik lana bera. Ez dakit bost egun ala sei ziren, behintzat epe horretan grabaketa guztiak amaiturik behar eban, jarraian beste talde batzuk



hartuko eben estudioa-ta. Lehenengo egunak niretzat alai eta umoretsu joan ziren, mundu eta hiri barrian induskari, musikariek eta teknikariek euren lana zelan egiten eben behatuz eta abar. Ea neuk noz hasi behar neban eta «lasai! —esaten eusten —. Lehenengo base musikala osatu behar da». Horrexen beste be ez nenkien. Azkenean egun bakarra geratzen zen ahotsa ezarteko eta orduantxe larritu nintzen. Ez nengoen ohituta eta nahitaez amaitu behar zen gau haretan. Oker neritxona edo hain gogoko ez nebana behar beste bider errepikatzeko ez zegoen astirik, baina gitxiago Bartzelonako puntatik lan amaitu bakoa besapean hartuta itzultzerik. Ahotsa ekinaren ekinez, eta batez be tentsinoaren eraginez, erabat mindu jatan eta azkenean erdi etsian amaitu neban. Hain aste alegretik hain amai larririk ez neukeen inondik be itxarongo.

Okerrena gero etorriko zen, diskoa entzun nebanean. Piezarik gehienei, batzuri batez be, abiadura nabarmenki bizkorregian eritxi neutsen. Neure aire jostari eta ikusmiratian hara-hona, musikarien grabaketari ez neutson larregi begitu, nire ardura zenik be ez baineban pentsatu. Gero ahotsa ritmo berean sartu beharra egokitu jatanean, bizkor usaina somatu neutsen, baina berandu zen eta, egia esan, azken eguneko zurrunbilo presatian ez nintzen jabetu be askorik egin. Diskoa entzutean, lotsatu egin nintzen, «Nora hoa arrapalada horretan?» pentsatuz. Inork ez ninduen, noski, txarto egitera behartu, neu bainintzen teorian egile eta erabagidun, baina inesperientziak eta zuzentzeko astirik ezak urrats oker emonak euren hartan iztea ekarri eben. Gauzak ahal den lez egiten dira eta eginaren damurik ez daukat, baina lehenengo lanak nahikoa lotsaturik itzi ninduen.

Kontratua be nobatadatzat jo daiteke. Berrogeta hamar mila pezeta izan zen eskeintza. Ez nenkien asko ala gitxi ala zer zen, pentsatzen be hasi barik baietz esan baineban. Ez nintzen konturatu kopuru horregaz egile eskubideak saltzen nebazenik be. Aurrean ipini eusten papera sinatu neban eta aurrera. Ziur naz

paper ha, gaur ikusiko balitz, kontratu zelebrea litzatekeela, baina ez dago ikusterik. Ez dakit neure kopiarik jaso neban be eta, halan bazen, galdua dot. Handik urte askora, kontratuaren kopia bat eskatu neutson disketxeari, baina ez dabe emon gura. Ezta erantzun be. Disko haretatik ez dakit zenbat ale etara ziren, ez zenbat saldu ziren, ez ezer.

Bigarren diskoa be IZ-gaz etara neban, larogeta bian uste dot. Artean Fernando Unsain, lehen diskotik harako harremonaz ganera, musikari lez be banerabilen herriz herriko emonaldietan. Ordurako, grabaketa estudioa muntatua zeukan Donostian eta hantxe hasi ginen HERRIKO PLAZAN izeneko diskoa grabatzen. Bertsoak eta koplak, bietarikoak sartu genduzen, gitxi gora behera herriz herri egiten genduzen jaialdien antzeko zeozer, baina gai orokorrakaz. *Lemoiz, Tejero, Reala Nagusi* eta horrelakoak. Kopletan be bardin: *Iparragirre, San Ferminak, Porruzko litania* eta abar. Disko honetan esperientzia gehiago neukan eta lana itxurosoago egin genduen, baina ez neure gustura, kontatzen hastea merezi ez daben arrazoiakaitik. Oraingoan ez nebazen egile eskubideak hain inozo saldu, baina kitantzak nahi ebenean eta nahi eben moduan egiten ebezen, ezetako baliorik ez zeuken faktura orrietan. Lehen kobrantzan, eskuz idatzitako zenbaki batzuk besterik agiri ez eban koartila bat sinatzeko ipini eustenean, harritu nintzen, baina sinatu neban, lagun moduan tratatzen baikinen. Dudaren bat azaltzeak mesfidantzazko egintza bat esan gurako eban eta hori bat-bateko une ezusteko horreitan biolentoa izaten da. Gero be halakoxe paper gauzeztanak sinatzen jarraitu neban, abiakeran egiten ez dena martxan zuzentzea gatxago izaten baita. Eta datu bakarra beti be zenbat kitatzen ziren izango zen, inoz be ez zenbat editatu ziren ez zenbat geratzen ziren saltzeko. Nahizta egile eskubidedun izan, bigarren disko honen argitasunik sekula ez dot jaso. Honezkero zirkulazinotik aspaldi erretiratua izan behar dau, agortuta ez badago, urte piloa baita ezelako kitantzarik luzatu ez daustela.



Lehen diskoaz askotan galdetzen neban ea MENDITIK MUNDURA zelan zihoan eta abar. Sekula ez neban argitasunik jaso. Ihespide inkonkretuak beti. «Lantzean ale bat eskatzen dabe, baina, badakizu, lan mota honeik oso minoritarioak dira». Proiektu ruinoso bat izan zen itxura guztia. Sinestu egiten neban, ez baineban egindako lanagaz konfiantza handirik, eta batez be ez jatan burutik pasetan engainatu behar ninduenik. Urte mordoa joan zen eta hara non larogeta hamabian (hamabosgarren urtera) telefonoz deitzen dausten, konpaktu batzuk etarateko baimena eskatuz. «Joño! —pentsatu neban —. Urteetan alerik saltzen ez eta orain konpaktuak?». Diskoa grabatu zenean, konpaktuen usainik ez zegoen ondino. Geroagoko sistema da hori eta beharbada horregaitik deituko eusten, kontratu batean ez baitaiteke sar ondino bere esistentziarik kontenplatzen ez den produkturik. Ez dakit. Baietz erantzun neban behintzat. Halan be, artean apur bat zailduta bainengoen, ez jatan bape garbia iruditu telefonoak dakarzen eta daroazen berben bitartez eginiko tratu bat, ez paperik ez ezer barik. Eskubideak lehen sasi-kontratu haretan salduak neukazenez, pentsatu neban deferentzia soilez deituko eustela. Gero harritu nintzen konpaktu haien egile-eskubideei zegoken ordain-papera bialdu eustenean. Hamar mila hogerleko ziren. Paperak ez zeukan ezelako agiri eiterik. Eta beti lez, ez zenbat etara ziren, ez zenbat gelditzen ziren, ez etxearen zigilurik, ez sinadurarik, ez ezer. Sukaldeko paper bat, edozein umek idatz zeikeena. Beti halakoxe paperetara ohitua banengoen be, pentsatu neban: «Oingoan ez, ba! Honeik eztozak gaozen sasoien gixonari bieltzeko fakture moduek!». Eta horixe azaldu neutsen, hots, ez nebala kobratuko, behar den moduko orria eta behar diren datuekin luzatzen ez baeusten. Hortxe amaitu zen dana. Ez ordaindu, ez erantzun, ez ezer. Hartzedun izatea pozgarri bada, betiko abantailan geratu nazela uste dot.

Hirugarren diskoa be, ANJE DUHALDE AMURIZAREN KANTARI izenekoa, barriro IZ-an etara genduen, nire eri-

txiaren kontra. Letra guztiak nireak ziren arren, disko honetan neuk ez neban kantatu, baina aurreko oker guztiak konfirmatu ziren. Diskogintzan ez dot zorte handiegirik izan, baina, askoren gatxa ergelen martxa bada, apenas bakarra nazen. Disketxe horrek ni baizen zapuzturik edo zapuztuago laga dituenakaz exkonbatienteen batailoi bat sor leitekeela ikusi dot.

# 7. Lehenengo txapela

## 1980KO TXAPELKETA AURREA

Hirurogeta hamaseiko udabarrian plazan estrainatu nintzenetik larogeiko txapelketara bitartean, transizino demokratikoa deritxona gertatu zen. Urte irabiatuak eta berotasun handikoak izan ziren. Giro horrek bertsolaritzan eta entzuleengan nahitaez izan behar eban eragina. Bertsolaritza gehiegi politizatzen ari ei zen. Ez dakit hori noraino den egia, bizi guztian ari naz gauza bera entzuten-da. Frankismoan horixe eransten eutsen gerra osteko itomenetik eta «euskaldun fededun» dotrinatik haragoko aitamenetara ausartzen hasi zirenei. Frankismo osteko lehen urteetan bardin eta oraintxe be kalaka bardintsuak darrai. Liberalen eta karlisten garaietan zer izango zen ez dot pentsatu nahi, daukaguzen erreferentzia ugarien arabera, alkar jaterainoko berotasun politikoa agiri baita bertso paperetan. Gertatzen dena orduan eta geroago be plazan eta bat-bateko bertsogintzan orain baino askoz gitxiago eta nahikoa eremu mugatuan kantatzen zela, ez baitzegoen hara-hona ibilteko modurik. Eguneroko bertsolaritza ez zen hainbeste entzuleria baten aurreko ekitaldi publiko bat, taberna eta sagardotegietako denporapasa partikular samarra baino. Bertsolaritza haren jardun nagusia eta, zelanbait esateko, profesionala, bertso jarrietan zegoen eta horixe da gugana iritsi dena. Euskal Herrian bertsolaritza beti egon da oso politizaturik, komisinoz edo omisinoz. Batzutan bildurrak gehiago agindu dau eta bertsolaria isildu egin da. Orduan zerbaitera ausartu dena bertsozale batzuk eskertu egin dabe, beste batzuk difamatu, politikotzat salatuz. Nik uste dot, aurrean dagoen zerbaiti buruz, esa-

tea zein isiltzea, biak direla egintza politikoak. Susmoa daukat, politizazinoa zer negatibotzat joten denean, zentzun bateko politizazinoa bakarrik salatzen dela, norbere alderdikorik ez dagoelako, edo dagozenei isiltzea hobeto datorkelako. Nik ezagutu dodazenetan, ezingo neuke esan zein aro izan den politizatuago, baina bai ikusi dot bertsolaritza despolitizatzen ahalegintzen direnak, orain, lehen eta gero, oso ideia politiko edo konfesional identifikatuen bozlari direla.

Larogei aurreko urteetan, entzulea batzeko berotasun handiagoa zegoela esan neike. Gaur pentsatzerik ez dagoen jentetzak pilatzen ziren edozein jaialdi edo plaza koskorretan. Giro politikoagaitik? Ez dago dudarik frankismo ankerraren mendeku bat izan zeitekeela. Jentea berotu egiten eban urteetan isilik zerdana agirian entzun ahal izateak. Plazak eta pilotalekuak ganez egiten eben. Bertsolaritzaren «booma»? Hori be bizi guztian entzuten ari naz. Belodromoa lehenengo aldiz beterik ikusi dauenak halakorik inoz ez dela gertatu pentsa daike, baina Bizkaiko Arenalean edo Eibarko Untzaga plazan probintziako final soil batean hainbeste jente edo gehiago ikusi ebenek gauzak beste ikuspegi bategaz baloratuko dabez. Billabonako desafioan egon zirenek zer esango ete leukie?

Nik dakidana da esaten ari nazen urteetan entzulea gehiago eta errezago batzen zela. Beharbada bertsolaritza gaur baino homogeneoago zen, hots, entzuleria ez zen hain anizkotxa eta bertsolariak be ez. Eta batez be honeik ez ziren orain baizen gazteak, eskolatuak eta gehien bat urbanoak. Gogoan dodana orduko saioen irudia da. Gehien bat saio libreak ziren, plazakoak behintzat. Nik neuk Lopategi eta Azpillagaren ondoan askotan kantatu neban. Urte bolada batean hirukote jakina ginen, Bizkaian batez be. Beharbada, danak jota, orain baino saio gitxiago egingo zen, baina edozein domeka arratsaldetan, edozein auzotan, jente piloa batzen zelako inpresinoa daukat. Barruko jaialdietan be, Deba Garaia adibidetzat harturik, Aretxabaleta, Arrasate, Bergara, Oñati... pilotalekuak edo aretoak ganezka oroitzen dodaz. Gaur halako betekadak Oñatin bakarrik itxaron daitekez.



Segurrenik orain urtean zehar bertso gehiago entzungo da, bertsolariok askoz gehiago gara eta entzuleak be baietz esango neuke, telebista eta dana jo ezkero. Orduan, esaterako, ez zegoen bertso afaririk. Alkarte gastronomikoetan eta abar, izaten ziren, bai, bertsolaridun bazkari edo afariak, baina bertso-afari formularen usainik ez zegoen. Bertsolaria jaiaren osagarri zen, ez jaiaren arrazoi. Hogei urteotako eboluzinoan bertsolariak gehitu diren dudarik ez dago, bai kopuruz, bai jatorri ezbardinez. Gazteen artean ia danak eskolatuak dira eta gehienak urbanoak, hots, kalean jaio eta haziak. Entzulea be ez dago dudarik aniztu egin dela, batez be gazteen afluentzia dela bide. Baina bertsozaleen kopuru osoa, hots, bertsolariak zuzenean entzutera mogitzen dena, handitu ala txikitu egin den, horixe ez dakit norantz erantzungo neukeen.

## TXAPELKETA BAI ALA EZ

Arestian azaltzen saiatu nazen kontestu guztiorren barruan txapelketa hotsak entzuten hasi ginen. Euskaltzaindiak, urteetako etenaldia gaindituri, barriro abiarazo gura eban jokua. Ordezkari batzuren bitartez, bertsolarien aldartea haztatzen hasi zen. Ez eben errez euki txapelketa antolatzen, bertsolari ibiltunik gehienen artean muzinez ikusten baitzen. Bertsoa ez dela jokua, jokua ez dela errenta, errentak kultura hondatzen dauela... bertsolaria trebea izan da bere komenentziak arrazoi handiz jazten. Funtsean gertatzen zena zen asko dabilenari ez jakola interesatzen bere hegemonia erosoa pertubatzeko nobedaderik eta gitxiago errenta on bat galtzeko arriskurik. Eztabaida handia eta beroa sortu zen. «Zertara zetorrek Euskaltzaindia bazterrak endredatzera? Zergatik ez diate sermoi txapelketa bat antolatzen?». Beste asko, ostera, plazaren inbidian zegozen eta mogimentua gura eben,

aukera bat, irabazteko arrisku bat. Gora gogoan dabilenak gauzari eragitea gura dau, gero, hara heldutakoan, oinetan dardararik gogoko izango ez badau be.

Entzun eta obserbatu egiten neban. Artean nahikoa goian nenbilen, plazen kopuruan behintzat, eta bestela be ohartua nintzen entzuleengan, aldeko edo kontrako, espektazino handia sortzen nebala. Argi neukan, txapelketarik antolatzen bazen, parte hartu behar nebala. Alde batetik, jente askoren maiseoa bentzutu gura neban. «Liburuko bertsolaria» nintzen, «eskolari eta politikari eskerrak dabilena». Bertsolaritzaren historia eta bertsozalearen sentiera ondo ezagutzen neban, baita maitatzen be. Askoren nitazko usteari bidezko neritxon, areago ondino, kontrobertitua izateak harrotu egiten ninduen, nahizta batzutan, egia esan, asko mindu.

Gogoan dot, txapelketa aurreko agorrilean bertan, ez naz gogoratzen zein egunkaritan, zelako iruzkina etorri zen Bilboko Aste Nagusiko bertso jaialdi bat zela-ta. Ni be karteleko nintzen, orduko bertsolari puntakoen ondoan. Orduan «puntakoak» esaten zena gaur «elitekoak» dira. Modernotuz goaz. Egunkari batek, programaren propagandan edo, «los mejores versolaris de la actualidad» edo horrelako zerbait jarri eban. «Los mejores» behintzat. Egi ala guzur, propagandaren ohiko formulak dira horreik, zeozeri garrantzia emon gura jakonean. Irakurle bateri ez jakon askorik gustatu eta hasarrez idatzi eban egunkarira, gitxi gora behera esanez: «¿Cómo se puede decir que participan los mejores versolaris, estando Amuriza entre ellos?». Morroi honeri kostako jakon handik lau hilabetera jantzi neban txapelari karinoz begiratzea.

Nire bitzitzan, bertsolaritzaz ganera, beste gauza garrantzitsu asko eta abiada bizkorrean zebizen eta, bertso munduan kontradikzino harri nintzela jakin arren, ez ninduen hainbeste afektatzen. Normaltzat ikusten neban jenteak nire balioa txapelketan probaturik ikusi gura izatea eta, parte hartzera moralki beharturik sentituz ganera, animoso nengoen, edo ez neban albora geratzeko arrazoirik ikusten, orduantxe emongo baineban benetan nigazko eritxia okerragotzeko bidea. Ez neukan dudarik txapelketaren bahetik pasatu beharra neukala. Ganera, egia zuzenago esateko, maila honetako gogoetarik ia ez jatan bururatu be egiten. Txapelketari eragiten hasi zirenean, gogorik ez zeukana ez joatea bidezko ikusten neban, nahizta jarten ziren arrazoietan ardura sutilagoak usnatzen nebazen, eta gogoa zeukana joatea be bai. Neure buruari soilki esaten neutson: «Hi ez bahoa, nor joang'ok, ba?». Entzuleagazko zor bat be sentitzen neban, inongo azterketa barik figura egin ninduenari ordain bat eskeintzekoa edo. Beharbada neu be lasaiago ibiliko nintzen, txapelketa kontutik aitatu ez balitz, baina bestetik ekimen hareri deigarri eta eragile neritxon.

Garai haretan ondino gehien bat librean kantatzen genduen, baina kartel handiko jaialdiak, gai jartzaile eta guztikoak, indarrez sartzen ari ziren. Gogoan daukat, bertsolari gehienek era barriari erreparo handia eutsoenean, gaiak emondako saioen apologista egiten nebala. Ondo zegoela, gai ezbardinak kantarazoten ebazela, neurri, doinu eta modalite ezbardinetan luzitzeko (bakarka, binaka, hirunaka...) modua emoten ebala eta horrelakoak. Bertsolari eta bertsozale askok uste eban jaialdi mota ha neuri komeni jatalako defendatzen nebala eta maiz entzun behar izan neban, erdi olgetan-benetan: «Bai, ba! Hi liburuko bertsolaria haiz-ta!». Baina bertsozalea aisa menperatzen neban, galdetuz: «Heuri ez al zaik gustatzen? Bertsozaleen gogoko ez izanda, nola gertatzen dituk honelako betekadak jaialdietan?». Argumentuak ez zeukan bueltarik. Bertsozaleei gustatu ezkero, barriz, bertsolarien muzinari euskarri gitxi geratzen jakon.

Horrez ganera, herri eta auzoetan bertsolarien gai jartzaile egitea oso bistosoa zen eta euskalduna, oro har, jente aurrerako oso uzkurra bada be, beharbada izakera horrexen kontra-efektuan indarturik, baztar guztietan izaten dira zeregin luzigarriak hartzeko desiatzen dagozenak. Faktore honek asko lagundu eban

gaidun jaialdiak zabaltzen, sarritan plaza eta okasinorik desegokienetan musturra sartzen ebela. Zer ikusi haxe kopiatzen errimeak garen herri honetan, oso denpora laburrean gai jartzaileen plaga bat zabaldu zen, balantza hutsetik larregiko musturrera eroanez eta bertsolari askoren muzinari arrazoia emonez. Egia esan behar bada, oso bertsolari klasiko batzuk be gai jartzailearen laguntasuna eskertzen eben. «Bestela zer kantatu behar diagu, ba, gaur hemen eta bihar han? Gai jartzaileak behintzat zeresana berak ekartzen dik». Urte batzuk igarota, saio librearen apologista bihurtu nintzen. «Heu hintzen, ba, gaiak jarritako jaialdien defendatzaile nagusia!». Egia da, baina proportzino kontua zen dena. Modalitate biak konbinazino orekatuan ez badabiz, bertsolaritza ez doa ondo. Orain, bertso afarien modalitatea prestigiatu delarik, oreka hobean gabizela uste dot.

Arestian esan dot Euskaltzaindiari kostatu jakola txapelketa antolatzen. Hemen hitz, han eztabaida, batzar negoziatzaileez ganera, bazebilen azpi olatu ugari, ekimena atzera bota nahi eben eta aurrera etara nahi eben indarren artean. Euskaltzaindiko ordezkariak apur bat lotsabako jarri ez balira, ez dot uste burdi harek aurrera urtengo ebanik. Azkenean, partaidetza edegiko txapelketa ezinezko edo oso bideragatx ikusirik, hamaseiren artean jokatzea erabagi eben. Izena emon genduenon artetik, erizpide batzuren arabera, hamaseiko bat eta zenbait ordezko izentatu ebezen, finalerdi bi eta finala izango zirelarik.

Txapelketaren baietza eta saioen datak erabagi zirenetik, jokurako prestatzen hasi beharra zegoen. Zeozer egiteko ilusinoa gehiago neukan huts egiteko bildurra baino. Hau be bai, noski, ondo jabetzen bainintzen lan itxurosoa egin ezik, nire bertsolaritasuna dudan jarten edo beste barik ukatzen eben detraktoreen kanpaiek zabal eta ozen joko ebela. Halan be, jarrera hori bertsolaritzaz beste eritxi edo aurreritxi batzuri egozten neutsen, halan-zelan arrazoi politikoei, jatorri bizkaitarrari, edo soil soilik zuzenki ezagutzen ez ninduenaren informazino okerrari. Txapelketan danek eta zuzen ikusiko ninduen, bertsozale guztiek maite daben proban, eta erronka ha, bildurtzen ninduen arren, ilusinoz hartu neban, susmatzen baineban lan ona egin neikeela.



## PRESTAKUNTZA

Zelan prestaturik? Hortxe zegoen kakoa, orduan eta beti. «Zer prestakuntza egiten dozu txapelketarako?». Itaun hori egin dausten guztian ez dot erantzun zehatzik emon ahal izan, euki be ez baitaukat prestatzeko sistema zehatzik. Zehaztasun bakarra erriman dago eta ez da gitxi. Hori bai lan daiteke, oso berba moltzo konkretuak baitira. Zeintzuk oin diren ohikoak, topikoak, interesgarriak, originalak... zeintzuk balio daben defentsa zabalerako, hots, edozein gauza errez esateko, zeintzuk diren mugatuagoak, beraz, arriskutsuagoak, baina asmatu ezkero, efektu indartsuagoa daukatenak. Aditzen, adberbioen, izenordainen, adjetiboen eta izenen funtzionaltasun ezbardinak eta kategoria bakotxaren barruan be berba bakotxaren ahalbide eta konnotazino ezbardinak. Hori guztia lan daiteke, berba moltzo guztiz identifikatuak izanik, ez baitago dibagatu beharrik. Arreta apur bat eskeini ezik, erriman be inertziak betiko oin eta bizioetara bultzatzen zaitu.

Errima lantzeak, bide batez, ideia barriak ekar daikez edo gitxienez ideia berak era ezbardinean esateko modua. Berbak gure buruan ez dabiz bala galduak lez, alkarregaz asoziazino naturalak eginez baino. Areago ondino, berbak ez dagoz hutsean, ideiei loturik baino. «Uso» hitzak beste barik hainbat gauza iradokitzen dau eta bardin beste edozein hitzek. Orduan errima menperatzeak eta barrituz joateak, sistema defentsibo bat ez ezik, adierazpide barriak emoten dauz. Larogeiko txapelketan HIZTEGI ERRIMATUA argitaratzeko zegoen arren, zirriborro nagusiak eginak neukazen eta orri fotokopiatuak bananduak ziren zenbaiten artean. Beraz, baneban alderdi hori lantzeko materiala

begien aurrean eta horixe izan zen nire prestakuntza zehatz bakarra, bakarrean eta bertsolari bakotxak bere erara egin daikeena eta zelan edo halan danek egiten dabena.

Horrez ganera, ohikoak diren prestakuntz jardunak dagoz, non talde bat batu eta froga ezbardinetan entrenatzen edo saioak egiten diren, puntuari erantzunez, oinak emonda, bakarrean, ofizioan eta abar. Nik horrelakorik ez dot inoz egin, ez baliorik ikusten ez neutsolako, nire bizitza beste martxa batean zebilelako baino. Maila horretan nire entrenamentu nagusia bertsotan ibiltea bera zen.

Azkenik, badago ideiak edo irudimena lantzeko be modu bat, azken urteotan aldarrikatzen ari nazena, baina oraindio arrakastarik lortu ez dauena. Bertso eskolak bertsolaritza lantzeko eta ikasteko gune lez nahikoa definiturik dagozen lez, ideiak lantzeko mekanika bat be molda daiteke. Bertsolari gaztetxo eta gazteen artean, hots, ikas aroan dagozenentzat, ikastaro bat edo beste emona naz, baina apenas inor konbentzitu den, kolektibo gisan behintzat. Zenbat eta gehiago tardatzen daben, denpora gehiago galduko dabe, baina, bakotxak berak ikusten ez badau, alperrik da ekitea.

Bada, horrez ganera, «bertsolarien lantegia» edo esan geinkeena, hots, plazan ugari dabizen eta, beraz, bertsotan badakiela suposatzen jakenen arteko bilgunea. Plazako martxa eta entzuleakazko hartuemon zuzena nahitaezkotzat joko neuke era honetako lantegian, bertsolariak bere plazako bibentzia egizkoak, ez abstrakzino imajinarioak, aporta daikezelako eta ondoren eta batez be taldearen gogoetak eta lanketak barriro plazan proba daikezelako. Asko samar ez dabilenak ezin dau, gurata be, dabilenaren tentsinorik eta interesik sentitu. Teoria laxoan dabilenak erdi denporapasatzat har daike bilgunea, ez dauka presarik ez gogoetak konkretatzeko anbizinorik, ez baitauka behar den tokian, entzuleen aurrean, probatzeko aukerarik. Nik honelako zerbaiten gogoa beti izan dot, berba egin dot horretaz, inoz proposatu be bai egoki nekusanari, baina buruera honek ez dau atxikimenturik lortu, nire



eskueran behintzat. Larogeiko txapelketa aurrean ondino hasten ari nintzen, plazan ez nintzen inor eta pentsakizun honeik geroko kontuak dira, erantzukizun baten jabe egin ondokoak.

Honeik holan, errimaren lantzeaz ganera, —oso lan garrantzitsua noski —, neure buruan pasatzen nebazen gogoeta informalez beste prestakuntzarik ez neban izan. Gogoeta informalak ez dau esan gura hutsala denik. Oso trinkoa eta emonkorra izan daiteke eta nire kasuan buruak lan asko eragiten daust, ez nik berari, berak niri baino, bertsolaritzan eta beste zenbait arlotan pentsaketa ezinbestekoa dodalako. Ez dot pentsatzen neuk gura dodalako, pentsamenak berak menperatzen nauelako baino. Hara-hona gabizen ordu luzeetan, kontzentrazinozko lan bat egiten ari ez garen bakar aldi ugarietan, lorik hartu ezinda gagozen ordu amaibakoetan, egunak badau hamaika une bide batezko, batzutan oso luzeak, motiboren bategaitik ohean egon beharra dagoenean, esaterako, zeinetan buruak, itzarrik badago, nahitaez zerbait pentsatzen jardun behar dauen. Milaka pentsakizun ezbardin euki arren, gura denari ekiteko sekula ez da astirik falta izaten.

Beste kontu bat da pentsaketa horreik guztiak garaunez harago noraino iritsiko diren, eta orduan pentsamena bere baitan zapuz daiteke, ur bako errotak bere burua jango leukeen lez, mekanismo ezinezko bategaitik abian jarraitzerik baleu. Beharbada norbere baitako gogoetaren intentsitate hauxe da edozetako elementurik ebazkorrena, baina normalean, pentsatzen ari zaren haretan eta haretatik bizi ez bazara, ez da pentsaketa metodikoa izaten eta gauza jakina da pentsamenak be bere metodoa —edo bere engainua— behar dauela, efikaza izan daiten. Inspirazinoak lagundu leizu, lanean harrapatzen bazaitu. Bilatu eta ezin aurkitzea askori gerta daitekio, baina alderantziz inori be ez. Kontzepzino magikoak bertsolaritzan ondino bere lilura daukan arren, berezkoak tiratzen dakienari joko dautso kanpaia, ez kanpandorrearen miresleari.

Txapelketa aurrean nire burua martxa handian zebilen eta ilusinoz be bai. Nahizta, arestian aipatutako hostilitateak bide,

bildur batzuk banebazen, ez neban sentitzen porrotaren mamurik. Izan be, porrota badenaren arriskua da, ez izan nahi dauenarena. Honek, txarrenean be, eskuan dauka lehen bestean geratzea, beste aukera baten zain. Ez daukat gomuta garbirik zer gogoaldartez nenbilen aurretik. Ostantzeko ardurak ugari neukazen: EGINeko langile izanaz ganera, Zornotzan HBeko zinegotzi nintzen lehenengo legealdian, musikariakazko jaialdi kontua esku artean nerabilen, bertsolari ibilera nahikoa ugaria neban, andragaiagaz orduantxe nenbilen uraren ganeko bitsetan, eta orduan eta geroztik sortu izan jatazen eguneroko hainbat eratako atzera-aurrerak eta militantziak. Ez neukan, beraz, ezjardunak ekarri ohi dauen kokoaren arriskurik. Txapelketa, beste nahasmen guztiaren erdian, zapla begien aurrean agertu jatan eta ez neban aurkezteko duda izpirik izan. Horretan ez neban denporarik galdu ez zalantzaren urduritasunik batu. Hori bai, lehenengo kanporaketa gainditu eta neure burua finalean ikusi nebanean, egundoko kemena sartu jatan. Lan kaskarra eginda, lehen takadan kanpoan gelditzearen bildurra uxaturik, hedeak jaurtitako zaldia baizen jarein sentitzen nintzen.

## FINALAREN EGITURA EZTABAIDAN

Finalaren arauak eta egitura zehaztea kostatu zen. Bertsolariei parte hartzeko bildurra kentzeagatik, lehen-bigarrenen sailkapena bakarrik jakinazoko zela erabagi zen. Arau hori bertsolarien presinoak eragin eban, antolatzaileek lehengo sistema ohikoa gurago izango baiteben, alegia, zortzitik lau aurrera pasatu, lautik bi eta bitik txapelduna. Formula honeri bertsolariek bildurra eutsoen. Izatez, zortzitik lau aurreratzean, ez dago atzean gelditutako lauren sailkapena emon beharrik. Beraz, nor geratzen zen azken, azkenaurreko, seigarren eta bosgarren, aisa ezkuta zeitekeen. Aurrera pasatzen ziren lauren artean, ez zatekean lotsagarri azken geratzea, laugarrena postu ondrosoa baita. Baina ez! Danak hasi eta danek batera amaitzea nahi eben bertsolariek, aldran heltzeak ahalbide misteriosen bat ekarriko ebalakoan, edo soil soilik disimulu handiagoan amaitzeko. Ez orduan ez inoz ez dautsot zentzunik aurkitu erizpide horreri, arrazoirik sublimeenez jazten bada be. Finalean azken geratzeko bildurra edo piramide egituran atzean geratzen danari aukerak mozten jakozelako argudioa beste arrazoiei nagusitu behar bajake, finalera sartzeko aukeratik kanporatuak izan diranek zer esan behar dabe? Inozokeria iruditzen jat lehia batean norbere burua ezkutatzera sartzea. Halan be, esan dodan lez, laukote bat atzean laga daiteke, sailkapenik emon barik, azken batez, arreta nagusia lehenengo lauren artean eta gorago lehenengo bien artean zentratzen baita. Hirugarrenak ez al dau beste jardun batzutan podiuma zapaltzen? Laugarrena ez al da postu ohoragarria?

Argudio honeik eta antzekoak alperrik izan ziren eta, bertsolarien gogoa nagusitu balitz, amaiera planoa izango zen. Zortziren lan bardina amaitutakoan, txapelduna eta txapeldunordea izentatu eta etxera. Horrexeri bai ez neutsola inongo funtsik ikusten, txapelketaren gailur unea, entzuleak gehien estima zeikeena, mozten baitzen.

—Gutxienez lehen-bigarrenek egin dezatela azken saio bat, txapelketa emozio-goran buka dadin!

Horixe zen etengabe insistitzen nebana. Antolatzaileei, piramide egitura galdutzat emonik, formula hori hobeto begitantzen jaken, baina ezin eben bertsolarien eritxiaren aurkako eredurik inposatu, txapelketa aurrera etarako bazen. Bertsolarien aldetik ez dakit zenbatek indar egin eban puntu honetan, baina uste dot neure ekinak lortu ebala gitxieneko proposamen ha onartua izatea. Halantxe erabagi zen lehen-bigarrenek azken saio bat egitea, txapelduna etarateko, aurretik zekarden puntuazinoa zekardela. Alegia, azken saioko puntuak aurretik lortuei gehitu-

ko jakezen, alde handia nahiz txikia izan. Ez zen, beraz, desenpate gisan aurreikusi, finalari azken distiratsuago bat emoteko modutzat baino. Bigarren geratzeko be bildurra behar al zen? Orduan ea zelan diseinatzen dogun danak txapeldun urteteko sistema bat. Alderantziz, ostera, azken saio horretan, txarrenean be bigarren geratzeko segurantzak gehi txapeldun urteteko probabilitate handiak kemena eta lasaitasuna nahitaez jaso behar ditu eta, egunean zehar ondoen ibili direnak kinka irabazle horretan jarten badira, kalitateak gora egitea probablea da eta emozinoa handitzea guztiz segurra.

Beste zenbait kontu txikiago be eztabaidatu zen, (doinurik gehien erabiltearen saria, adibidez, nahiko sari zentzunbakoa bera), baina gehien bat, txapelketa haren egituran, erabagi nagusiak honakoak izan ziren: hamaseiren kopuru mugatua, finalerdi bitan zortzi finalista etaratea, finalean zortzirek goiz-arratsaldez bardin kantatzea eta puntuazinorik gehiendun biek, zekarden aldea zekardela, azken saioa buruz-buru jokatzea, eguneko puntuazinoari bien arteko saioarena gehituz.

## MOROKILA ETA LOA

Txapelketa aurreko egunetan, arestian aipatutako prestakuntzaz eta egunaren hurbiltasunak dakarzen ohiko pentsakizunez ganera, nire ardura nagusia bezpera gauean lo egitea zen. Nire loak atxaki gitxi behar izaten dau, galaxietara pasioan joateko, motibo kezkagarriengaitik nahiz pozgarriengaitik. Neure burua etsairik handiena bailitzan kontrolatu behar nebala sinesten saiatu nintzen, ez topikoak dinon «norbere burua gainditze» horregaitik, lagun bakarra bera nebalako baino. Lagun bakar hori bezperan batez be tentuz eta azpieskuz tratatu behar zen. Edo engainatu behar zen. Azkenean beste faktore guztiak, banan menperatzen saiatzea gudu aurrez galdua eta galgarria zela jakinik, gauean lo



egitera bildu nebazen. Hori lortzen baneban, nire lagunak bihamonean erantzungo eban.

-Hemen eittekoak eindde jjaozek. Eurreko egunetan eitten dokena eitten dokela, ez haz ixengo hazena baiño gehijjao ez gitxiao, baia egunien bertan ixen heinttike hazena baiño gitxiao, burue fresko ta deskantseu ez badaroak. Lo! Lo! Lo!

Banenkien hain ondo ezagutzen neban lagun bakar horrentzat erronka gatxa jarten nebala, baina okerrena ahalegin faltaz gertatzea izango zen. Ahal den guztia egin ezkero, libre zara aberia inprebisibleen atarian izten zaituen errudun-konplexutik. Ez da hainbeste ahalak egitea, egin izanaren ustea baino. Norbere burua engainatu behar da, baina tranparik egin barik. Helburu ezinezkoak mesprexatuz, gaitasun teorikoki posibleak bereizi behar dira, nahizta honeik be, aldez ondotik, besteak baizen ustel gertatuko diren susmoa izan, baina ondokotasuna ez da problema, orduan gertatzekoa gertatua izango baita, eta zorionez ez dau izango norbere erabagimena barriro engaiatzeko bueltarik. Eskerrak iragana ez dela zuzengarri, ze, gehienean emon dauskun minaz ganera eta ganean, ha berreraikitzeko eskuera bageunka, barriro porrot egiteko probabilitate guztiakaz, ez dakit nondik begiratuko geunskion etorkizunari.

Honeik guztiok ez nebazen, noski, holan zehazki pentsatzen finalaren aurreko egunetan, baina holantxe ziren. Pentsakizun molestoak euliak lez uxatzen nebazen. Euliak baino gehiago zirenean, ezpata-euliak adibidez, larruari zapla emongo neutson eta, huts egitea gertatzen bazen, gorputzak hutsik barik hartzen eban zartakoak beste tenple bat itziko eban. Ezpata-euliari xurgapenean sakondu arte eusteko ahalmena euki ezkero, helburu biak (eulia akabatu eta zartakoaz jabetu) lorgarri dira, bigarrena ganera efektu indartuagaz, minaren ganeko zartakoa ahazkatxago baita. Gorputzeko zirrituetan galdurik, edonondik ziztatzen zaituen mandeulia bada, barriz, (zartakoekiko erresisten-

tea bera, batez be erropa ganetik emoten bajako), orduan erantzi eta dutxa berora, negua baitzen. Hustubidea itxi eta parrastada batzuk hartutakoan, mandeuliak (bakarrik izorratzea ez jake gustatzen) ur ganean idiaren barrabiletan baino noraezago hautematen dozuzenean, emon urik beroenari (alde norberak paretik!) eta ikusiko dozu zelan harein zangoak, kontatzeko baino txikiagoak, astiro-astiro etsita zabaltzen diren, ze, ur hotzetan itoko diren zain bazagoz, jesarri lasai alboko komunean eta heldu otzaran daukazun libururik lodienari.

Mandeuliakaz ez neban arazorik izan, negua baitzen, eta neguan ez dago halakorik, ez ezpata-eulirik, eta dagozen euli banakak berez jausten dira. Beraz, emon ur beroari eta puntua: «Txapelketara narru / hutsik joan ezetz». Zegaitik ez dok «hutsik ezetz joan» edo «ezetz joan hutsik» jarri? Txo! Gauzak datozen moduan hartu behar dozak. Sekula ez jazak gura baizen erara etorriko, amai ona emon dautsoala ikusi arte, eta orduan iragana dok. Honelako ariketak, errimaren errepaso txikiak eta gisakoak, ez dago saihesterik aurreko egunetan, ez hainbeste euren balio efektiboagaitik, nahitaez pentsamentu haretara eskapatzen dautsun burua ardura larriagoetan jaustetik libratzeko baino. Egitekoa egintzat emotearen berrespen errepikatuak nasaitasuna emon daike. Kasu honeitan fatalismorik ezkorrena ez da prestakuntza txarrena. Ez dago zereginik! Beraz, ez daukat ezer egin beharrik. Kontua da buruari ez jakola itzi behar berak aberasgarritzat aurkezten dautsuzen, baina azkenean labirinto galgarri bat besterik izango ez diren bideetan barreiatzen. Aldi berean entretenigarriak be emon behar jakoz, ostantzean ihes egiten baitau, nora jo daikeen inoz ez dakizun ume bihurriak lez, eta hortxe dago kakoa, entretenigarri aldi berean konbintzenteak eta ez nekagarriak izatean. Umekeriak berba baten, baina gizonkeria lez aurkeztuak. Norberak jarritako puntuei norberak erantzun eta horrelako txotxokeriak. Nire egiteko bakarra bezpera lasaia pasatzea eta gauean lo egitea zen. Horretarako entzunda neukan morokila eta esnea onak zirela (esne epela logura emole) eta horixe izango zen nire afaria. Azkenean, nire prestakuntza nagusia morokil-esnetan bildu zen. Hortxe aurkitu neban klabea edo zertan zentratua.



Sasoiz oheratu nintzen, hamaikak aldean. Hirulau ordu aurrez galdu beharrekotzat jorik, lasai netzan neure mantapean, pentsakizunen abiadura saltariari ahalik hurrenetik jarraitzen. Espetxean ikasitako yoga posizino lasagarri guztiak probatu nebazen, pentsamena titare nimiño batean sartzen ahaleginduz, eta logura izan zeitekeela zirudien egoera lortzen nebaneko, kontrola be laxotzen zen eta titarea galdua zen. Ha eskuratzeko, barriro guztiz ernai behar zen eta laster aurkitzen neban, baina hutsik. Pentsamena joana zen, bigilantzia atenuatuaz baliaturik, nahi eban adar puntetan zabaltzeko. Umore oneko aldikadak emon dautson tximua oihanaren kapeluan harrapatzea lez. Onena da etzun eta begitu, eta norberak be haren zilipurdiez (tximukeriez) gozatu. Horretarakoxe nengoen etzunda luzetasun epel-epelean. Pentsamenari, jaramonik egin barik, dabilela izten badautsozu, gogaitu egiten da, ez baitaki bakarrik ibilten, eta laster hasiko da zu inguratzen, bueltan bueltan, eltxo erremediobako horreik lez, baina, honeik engainatzea ia ezinezko dela-ta, aurpegian zaplada mordo bat hartu barik behintzat, mantapean burua sartu eta zirritu bat izten badozu, han kokatuko jatzu (pentsamenaz ari naz) sur punta epelean (freskoan ez dau balio), Marigorringoren alderantzizko bidaia suabea eginez. Kontuz-kontuz eta begirik edegi barik sur puntara adi-adi begitzen badozu, barriro titarean sartzea errez lortzen da.

Gauerdia igaroa zen, ordu batak joak, ordu biak prebisino normaletan iritsi ziren, erbia baino itzarriago, nahizta begiak linboa baino itxiago. «Ez ete jjoat lorik hartu biher?» Galdera honek artegatzen hasteko unea adierazoten eban. «Horixe ez gero! Lorik ezin b'ok, ez estutu behintzet!». Nire lo-xedea, galzorian ikustean hasia nintzena, beste xede batez trukatu neban. «Ezin ddanari itxi ta heldu deijjogun al danari. Deskantsuen hao. Begijjek itxi-

tte hao. Gorputze irebazten dekok. Burue martxan bajjabik, bijjetatik jjekuk irebazijje. Zegaittik artegatu bi'heu abantaille baten aurkikuntziek?». Goizeko laurak aldera nire erronka horretantxe jarten neban. Goizeko bostak ganean. «Ez ete jjoat bape lorik eingo? Horrek ezin jjok iñundik be ona ixen!». Hutsaren posibilitateak urduritzeko motibo serioa zirudien eta gogoan dot ordu horretan benetan larritzen hasi nintzela, jagitea pentsetaraino! «Orduntxe bai ez dokela gehiajjo begirik itxiko!». Tentazinoari eutsi neutson eta neure etzuntasun epel eta ahalik geldienean jarraitu neban. «Puta! Hauxe bi'jjuk oin, ez lo ez la! Tamaiñuko hondakiñe joango haz Baldara». Seirak ez nebazen entzun. Beraz, itzargailuak goizeko zazpiretan jo ebanean, ordubeteko loa egina neban. Arrazoi baikor eta sendoren bat atoan behar nebalako edo, nahikoa begitandu jatan eta neure burua salbo ikusi neban, nire prekauzinoek azkenean garaile urten ebelako! «Oin datorrela datorrena!».

### Baldara bideko gangar-haizea

Jagikera loka samarra izan neban, buruko zirkuitoan haizea sartu balitz lez, eta seinale ontzat ala txartzat jo behar neban zalantzak urduritasuna aktibatu eban, ez kontzienteegi. Haize lar sartu zen, antza. Ispiluko hortzak agresiboki garbitzen nebazela, begi inguruak eta bekoki azalak (belarriak ez ziren mugitzen, nahi eben baina) izugarriro tximurtzen eta burua albokada ohiletan ikusten neban, (hortz eskuila geldiaren kontrara haginak amorruz gastatzen ziren), baina ez ninduen ikaratzen. Dutxatu bitartean, puntu txotxolo batzuk jarri eta erantzunak airean itziz, —ixorra zaitteze! —, egun ona nekarrela sinesten saiatu nintzen eta sinestu egin neban. Ez nenkien zer eskertu gehiago, zazpi orduko itzarraldia ala ordubeteko loa. Bietariko batek on handia egin eustan eta besteak txarrik ez. «Piñu botaten joatie balitz be, baia bertso batzuk kantetako zer bi'hok, ba?». Erropak jantzi eta gehigarriak harturik, jake handia batez be, nerbioentzat txarrena hotza baita, (ez dakizu eurena ala hotzarena den dardara eta une horretan, zeure gorputzeko fenomenoen esplikazino garbirik ez badaukazu, —ez dautso ardura esplikazino okerrak izan arren, identifikaturik badagoz—, orduan galdua zara), neguaren edozein aurpegi txarri aurre egiteko moduan urten neban etxetik. Beste prebentzino guztiak ondo bete ondoren, jakerik ezak dana izorratzea besterik ez genduen behar. Zornotzan Bilbotik zetorren andragaia hartu eta Autzaganera igon genduen, neure jaiotetxetik hur, non hara joko eben beste lagun bigaz (espetxekide bat eta bere neska-laguna) bat egingo genduen.



—Zelan?

—Haixie zirkuito guztijjen jabe dabillela uste jjoat.

—Zer?

—Itzel!

—Irebazi ein bi'hok, eh!

—Galtziek bape ardurerik ez ixeteko tentuen najjatok.

Alde batetik ea nire kemen-erakutsiak halaxe gertarazten eban ari nintzen, baina kasu haretan nahia eta ahala nahiko hur nabari nebazen. Gau inparable baten ondoko argitasun baikorra sentitzen neban, ilunabarrak eta egunsentiak otartekoan hartu banindue lez. Sentsazino horren barri baneban aurreko esperientzietatik, baina baikortasun bulnerablea izaten da, eguerdirako nekatzen hasten dena. «Eskerrak ordubete lo eindde naoena!». Pentsamentu honek alarma guztiak baretzen ebazen. Gosari eder bat egin genduen (kontuz edanagaz, buru arinean kalte damugarriak eragiten baititu) eta laurok auto bakarrean abiatu ginen. Ez daukat ahazteko Orio ganean, Donostiaranzko aldasgoran, autopista baztarrean gelditu eta, txiza eginez, zelako uhuak eta eupadak egin genduzen, besteek niri laguntzearren segurrenik.

—Lar animoso ez habil?

—Hor konpon! Hau behintzet etxoskuk iñok kenduko.

Nire bizitzako gomutarik argienen artean daukat goiz haretakoa, txapelketa bera eta txapelketa ondoa baino askoz argiago. Gangartasun zoranga bat nabari neban gorputz osoan, ez dakit zerk eta nondik eragina. Ilusinoa, kezka, tentsinoa, ordu handien usaina, bertigo puntua, txapel posiblearen lilura, andragaiaren hurbiltasuna... dana ibiliko zen nahastean, hori ez dakit, baina garbi daukat exzitazino badaezpadako bat bizi nebala, eusten saiatzen nintzena, tamainu arriskutsuetara oldar ez zeiten. Harrezkero hamaika bider pasatua naz aldasgora haretatik eta erdi inguruko zelaigune ha, aldats itxura guzurrezkoa emoten dauena, nekez itziko dot atzean, larogeiko txapelketako goiz ganezkatuaz gogoratu barik.

## TXAPELKETA BERA

Txapelketako bertako gomutak masa nebulosoan gordetzen dodaz. Nonork halako zehaztasun bat aitatzen badaust, kargutzen naz, baina lehen planoan geratu jatana globaltasun oso bat da, indartsua eta ozena, baina ertzik bakoa. Ikustekoa baino gehiago, begiak itxita sentitzeko olatu bat geratu jat. Ez daukat gogoan nora begitzen neban. Pilotaleku jendeztatu bat, bertsolariok ilaran, baina ez itaundu noren ondoan edo nortzuren erdian, Iriondo oholtzan atzera-aurrera, non eta nogaz bazkaldu neban be ez daukat garbi, andragaiagaz bakarrik ala beste batzukaz, txapela nork jantzi eustan ez daukat gogoan, liburuaren bila joan naz, oroimena barritzeko, baina ez daukat edo ezin dot aurkitu, txapela eta eskulturatxoa non dagozen ez dakit... Honek ez dau esan gura ezaxola bat fingitzen ari nazenik, oroimena zeinu esternoen mende iztekoko baino harroago nazela baino. Nire arreta ez dago xehetasun bisualetan, sentipen bortitz eta unitarioan baino. Begiak ixtea aski dot, egun haretako indar guztiak kolpa nagian.

Baditut, halan be, laubost gomuta oso zehatz. Goizean izan neban une bat, ez dakit noz zehazki, halako konfiantza kolpe batek jo ninduena. «Ez habil txarto!». Oso kolpe laburra eta indartsua izan zen, inoz betirauna atxiki dozula iruditu jatzun zartada horreitakoen antzekoa. «Iruditu jatzun» esan behar da, orainean kokatzerako igaroa baita. Kolpea bera joan arren, sentsazinoa hantxe gelditzen da eta hainbaten goizeko saioaren azkenerantz gertatuko zen une haren ondorioa oso ona izan zen niretzat.



Beste gomuta oso argi bat «gizona ez da ogi hutsez bizi» gaian egin neban bakar saioaren amaia izan zen. Jesarri nintzenean, buruari heldu neutson, egindako lanaren sentsazino garailez, eta, txalo hotsak jarraitu egiten ebala ikusirik, zutundu egin nintzen, entzuleriari esker onaren gurra eginez. Nire aldetik oso erreakzino espontaneoa eta zinezkoa izan zen. Barriro jesartean, harrokeriatzat har zeitekeela pentsatu neban, batez be lerroan gengozen lankideen aldetik, baina eginda zegoen. Badot fatalitate txiki bat, aurrea hartzeko gauza ez nazen espontaneitateak ondoren berehalakoan oharmen zorrotzegira sometitu beharra. Batzutan emoitza faborablea gertatzen da, baina sarritan nahibage alperrekoa, joanarentzat berandu denak hurrengoa konponduko dauenik ezin baita itxaron.

Bakar lan haxe izan zen nik txapelketa haretara neroan erronka nagusia. Sei puntuko doinu barria zen, zortzi-zazpikoa. Zenbait kanta zaharretatik ezaguna izan arren, zortziko txikiaren eta handiaren arteko neurri ha ez genduen plazan inoz erabilten. Doinua espetxetik nekarren, Etxahun Barkoxekoari buruzko sorta bategaz (bertso hareik galduak daukadaz), baina plazan sekula probatzeke neukan. Neurri ezohikoa banenkien traidorea izan zeitekeela, baina arriskua asumiturik joan nintzen. Proba onez gainditu eta entzuleria hunkitzea lortu nebala ikustea egun haretako nire pozik handiena izan zen, txapela jaztearen hurrengo noski, baina hau ez zen lanen barruan sartzen.

Arrastiko ekitaldiaren hasiera be oso gogoan daukat. Azpillaga jaitonegi eta koloretsuegi zetorrela begitandu jatan eskiletan gora, bere puru handiari tenga-tenga. Alkarren ondoan toka-

tu ginen eta, jesarritakoan, itaundu neutson:

—Nun bazkaldu'ok?

—Alejandronien. Kaleraiño beteta jeuan. Ha zuan giruel! —erantzun eban bere sanoan eta agiraka tonuan esan neutson:

—Baia zelan joan leikek gixona Alejandronera, txapelketa egun baten!

Giro burrundatsu horreik, entzuleakaz nahastean eta janedanari erreparatu barik, munduko ederrenak izango dira, beste ardurarik ez denean, baina kontzentrazinoaren eta buru argitasunaren kontrakoenak begitandu jataz beti. Putzu ganeko saltoa putzu barrutik entseiatzea lez.

## AITAREN GAIA

Gomuta argienetako bat txapelketako azken lanean «aita» gaia jarri eustenekoa da. Gai ha, handik urte batzutara «Ikuska» izeneko laburmetraian garatua izanik, gogoanago eukitzea bidezko da, baina nire irudiak ez dira hainbeste filmakuntzakoak, (honeik ahaleginduta barritu beharko neukez: Antxon Ezeiza zuzendaria, Belokeko komentua eta oihanak, haizete handi bat, Santi Brouarden hilketa...), Baldakoak bertakoak baino. Gomuta honein arabera osatu neban gero filmeko gidoia. «Aita» entzunaz batera, bertan banengo lez gogoratzen dodaz hirulau segundotan nire burutik pasatu ziren pentsakizunak.

Lehenen neure aitaren irudia etorri jatan, baina ideia baztartu egin neban, sentipen handiegi eta lar kurutzatuetan nahasteko bildurrez. Gure aita espetxean nengoela hil zen, inondik be itxaroten ez nebala. Hiltear eta gero hila zela, ikustera ekarri ninduen Basortuko ospitalera, ez, ostera, etxera eta herriko hilerrira. Aitaren azken irudi hareik ikusi ez baneuz, bizirik eta umoretsu iraungo eban nire begietan. Orain, barriz, haren izaerari eta nire haregazko erlazinoari ez zegokozen irudi tristeak geratu jataz lehen planoan. Hau guztiau sentiturik, gaiari hortik heltzea galbide izango zela pentsatu neban. Ondoren «Jainko Aita» bururatu jatan, baina, neuk ideiagazko berotasun handirik ez sentituz ganera, ordurako fede horretatik guztiz desatxikia bainengoen, helduleku topikoa eta arrunta eritxi neutson. Ironizatzen hastea, barriz, arriskutsua eta inpopularra izan zeitekeen. «Ez! —pentsatu neban —. Enok hemen antxiñe itxiniko kartolari barriro heltzen hasiko».

Hurrengo neure aitatasun posiblea bururatu jatan. Oraindio ez nintzen arren, izateko bidean nenbilela eta abar, baina andragaia bera aurrean egoteak artegatu egin ninduen eta lorrinerako bidea ikusi neban. Denpora aurrera zihoan eta zeozegaz nahitaez hasi beharraren eskegitasun abismal haretan, ez baineban zeri heldurik ikusten, nire kontzientziatik at nonon bere kabuz pentsaketan ekin zion burmuin punta autonomoren batek zapla jaurti eustan «hemen bizirik balego» amaia, hasieran konplikatuegitzat baztartutako bidetik. «Da gero beste bi bertsoetan zer esan? Baia hasi ein bi'hok! Bota dagidan lelengoa ta gero ikusiko jjuk». Halantxe hasi nintzen neure aitari kantetan. Andragaia aurrean egon ez balitz, segurrenik neure aitatasunetik joko neban. Pentsakizunen segida guztiau nire oroimenean gardentasun eta intentsitate osoan markaturik gelditzearen arrazoi nagusia ez daukat dudarik bizi izan neban larritasun limitekoa izan zela. «Hemen bizirik balego» salbatzaile ha nonondik agertu ez balitz, zer izango zen pentsatzeak oraintxe be dardaratu egiten nau.

Lehenengo bertso ustez ondo biribilduaren eta entzuleen erantzun beroaren animuak laster ekarri eban bigarrena. «Nik egingo dut arbola handi / zuk emandako hazia». Ederra iruditu jatan. Zentraturik nengoen. Hirugarrena: «Niri jotako txalo guztiak / bidaltzen dizkizut zuri». Zenbait begitan mosuzapiak hautemateak «isuri» oina emon eustan azken aurreko punturako. Honegaz eta amaiera haregaz, bihozkada triunfala sentitu neban. Kantatzen hasi nintzen eta bigarren puntuaren azkenerantz (hama-

rreko handia zen): «Zein ixen dok azken eurreko oiñe?». Erdi pausa eginik, hirugarrenean aurrera ninoan eta, puta!, ezin inoh dik ekarri iheslari madarikatua. Azkenean halabeharrez ordezko bat zeozelan atara neban. Eskerrak azkena gogoan neukana. Oin ezabatu ez balitz, laugarren puntua honelako zeozer izango zan «Malkoak ere hainbat begitan / horra zugatik isuri». Aulkian jesa rriz batera gogoratu jatan. Bertsoak ospetsu egin ziren arren, pena harek ez daust inoz alde egin.

Txapeldun aldarrikatu ninduenean, poz zabala eta zabal korra izan zen, uholak ibaia ganezkatzen dauenean lez. Ez zen sentipen bortitza eta zehatza, ertzik bakoa baino, periferia han dituz zihoana. Alde batetik aurrerago be somatzen neban, huts larriren bat egin ezik, irabazle izango nintzela. Lanak amaituta koan, ia segurtzat neukan. Bestetik tentsinoa nabarmenki laxo tua sentitzen neban. Dagoaneko ez zegoen sentsazino bortitzen preminarik, ezta ahalmenik be. Baretasun gozatsu eta luzagarri batean sartu nintzen, jakinik unea barritzeko eta haretaz biziki gozatzeko nahikoa asti izango nebala, egunaren zurrunbilotik biha mon oskarbira desenboka neintenean. Txapela jaztearen unea eta ondorengo guztia areago gogoratzen dot gero ikusitako argaz ki eta filmakuntzetatik. Egunekoa bera aire-suspentsino bat lez geratu jat, oso atsegina, baina xehetasun zehatzik bakoa, ame setako erotismoaren antzekoa. Ahaleginak egin behar dodaz buel tako bidea eta non eta nortzukaz afaldu neban gogoratzeko.

## AITAGINARREBAREN LARRITASUNAK

Bai, ostera, oso gogoan daukat andragaiaren etxera heldu gine nekoa. Ahizta biakaz eta euron amagaz, oraingo nire amaginarre bagaz, joan nintzen. Uste dot inguru haretatik mogitutako baka rrak izan zirela. Ondino gitxitan sartua nintzen Erreka baserrian, lehenago bai, «Don Jabier» nintzenean. Hango aita, Manu Erre



ka, aspaldi oheratua zen. Gaixo samar zebilen eta ez zen Donostiara etortzen ausartu. Eskilarak igon eta oholezko koltza ozenean triki-traka, atea edegi, argia biztu eta atalburutik airean jaurti neutson trofeoa ohera, hots eginez: «Hemen dakargu, ba, txapela!». Ha bai poztu zela, inor poztekotan.

—Hemen nao ni arratsaldeko zazpiretatik —esan eban.

—Zelan hain goiz?

—Hori kartzela kontuori aitxetu dabenien, ernegeute oire aldein ddot!

Txapelketa irratiz jarraitzen ari izan ziren eta ez eben, orain telebistan lez, irudi zuzenik ikusten. Saioaren azkenean, kartzelako gaia iritsi zenean, honelako zeozer entzungo eban:

—Orain Amuriza kartzelara eramango dute eta...

—Sanababitx! —birao eginez zutundu zen gizona sutan, eskaratzean —. Hortxe be ein jjok horrek biher eztanen bat!

Amorruz eta atsekabez ohera alde egin ei eban. Harek ez zeukan kartzelako probaren ezagutzarik eta, hitza entzunaz batera, txarrena pentsatu eban. Bera be gerran eta gerrosteko kartzeletan gorriak ikusia zen, gorria zelako, eta horretan odol berokoa, eta puntuan jarten zenean, kontulari zelebrea izanik, txizak egin genduzen barreka, haren oheratze eta pentsakizunen barri entzuten. Gau haretan pozak eta graziak bat egin eben.

Honeixek dira larogeiko finaleko nire gomuta ez xehetasuntsuak, baina bai indartsuak. Hortik gora nire oroimenean deskribapen gatxeko sentipenek bakarrik erregistratu ziren.

## TXAPELKETA OSTEA

Txapelketa osteko lehen egunak neure barruko poza ordenatzen egin nebazen. Egin eustezen alkarrizketa guztietan gauza bar-

dintsuak esango nebazen. Lehenik, oso pozik nengoela irabazteagaitik, nitaz zebizen errezeloak gainditzea lortu nebalako. Orain lasai ibil neintekeen edonon, zerbait banintzela tranpa barik erakutsi ondoren. Bigarrenik, txapelketa guztian bat be hutsik ez egin izanak egundoko satizfazinoa itzi eustala. Neurrian, erriman eta hizkuntzaren erabilera zuzenean esan nahi neban. Hirugarrenik, izugarrizko poza emoten eustala ahozko hizkeran betebetean sartzen zen jenero bat euskera batuan eta koherentzia osoan burutzea lortu eban lehenengoa izateak. Eta azkenik, gauzaren bat edo beste hobeto egin ahal izanaren pena eta guzti be (aitaren gaiko «isuri» eta gisakoak), oso harro nengoela egindakolanaz eta entzuleengan sortutako erantzunaz.

Honeixek ziren gitxi gora behera esaten nebazenak. Euskera batuari buruz esan behar dot erabagi ha alde oso ezberdinbik motibatu ebela. Batetik orduan euskera batuagazko konbikzino eta baikortasun handiagoa zegoen edo nik behintzat halan bizi neban. Gero ikusi dogu zelanbaiteko sinesmen ha makaldu egin dela, ezinagaitik edo muziganaitik erizpideak asko erlatibizatu direla. Sarritan euskera batua bizkaitarrek egiteko dela emoten dau. Gaur be Euskal Herri mailako ekitaldi batean ez neuke euskera batuan egitearen dudarik izango, baina larogeian erabagi egin behar izan neban. Egia esan, ez jatan askorik kostatu, batuaren aldeko hautua garbi baineukan. Beste aldetik, Euskal Herri mailako ekitaldi batean bizkaieraz kantatzeak zer ekar zeikeen? Banenkien hori egitea zilegi ez ezik, normala izan zeitekeela. Baina zenbatek eta zenbat ulertuko eben, bizkaierarik batuena eginda be? Zer esanik be ez, euskalkiaren azpibideetara apur bat jasten hasi ezkero. Ez neutson gozotasunik ikusten Donostiako finalean entzulerik gehienek erdizka eta askok oso gitxi ulertzeko perspektibari. Beraz, Bizkaian egin zeitekezen kanporaketa saioetan be batuan egitea erabagi neban, Euskal Herri mailako jarduna zelako. Eta horixe zen, hain zuzen, ikusarazo nahi neban alderdi garrantzitsu bat, alegia, euskera batua



ezinbesteko tresna nazionala dogula. Ezinbestekoa eta praktikoa, bertsolaritza lako alor herrikoian be.

## Bizitzako musturrekorik mingarriena

Neure pozean eta hamaika asmotarako konfiantza adoretsuan, ia infantilean, jarri nintzenean, ez neban askorik pentsatu bizitzako musturrekorik mingarriena gertatzear zenik. Ez zen dana batbatekoa izan, kolpez kolpe baino, bakotxari behar zen uneraino heltzeko astia emonez, ezpata sartuari barruan astiro-astiro eragiteak eransten dautson (suposatzen dot) minberatasun krudelean. Segurrenik neure inozotasunak eragotzi eban danaz batera ez jabetzea, baina zelan otu behar jatan neure baitan lasterka sentitzen neban erreka gardenak halango kutsadura ekarri behar ebanik? Lehenengo abisua begi-begietan daukat. Orduan EGINen lan egiten neban, Bilboko erredakzinoan, eta behin igogailutik urten eta atean sartzera ninoala, kanporantz zetorren idazle bizkaitar oso ezagun bategaz topo egin neban, nahikoa adintsua bera. Lehenengo berba topikoak eta bigarreneko zorion emoteak amaiturik, hirugarrenean sano-sano itaundu eustan:

—Gai batzuk aurrez jakinak izango zenduzen, ezta?

—Aurrez jakinak? Txapelketa baten? Ez nebazen bihamonean halako axubetak alperrik euki!

Axubetena egia zen. Gorputz osoa jipoitua neukan, batez be kokot ingurua eta bernetako bolak. Lan mental tentsoak muskuluak majo atezatzen ditu, antza. Horixe esan neban, akenaren tripalak esan neikeen letxe. Harriduran eta ezustean josita itzi ninduen, zer erantzun ez nenkiela. Agur eta beste bat arte, ni barrura eta bera igogailura. Neure mahairantz ninoala eta gero bertan jesarrita, belarria errepika ekinkorrean zebildan. «Aurrez jakinak?... Aurrez jakinak?... Aurrez jakinak?». Lanean, bazka-

lorduan, arrastian, etxerakoan... galderak ez eban belarri zulotik alde egiten. Txantxa bat izan ete zen? Bat-bateko burutapen baziloi bat, uneaz haragoko garrantzirik ez zeukana? Bere burutik esan ete eban? Ala jasotako komentarioak egiztatu gura ebazen? Errezelo itzela sartu jatan. Solas luzean pasadako broma soiltzat har zeitekeena, ateko kurutzatze llabur baten kortesian eta haren esakera bat-batekoan, okasinoari joaten itzi nahi ez baleutso lez, zeozer serioagotzat hartzekoa zela jotzen baneban, hurrengo bueltan arminkeria ziztrintzat baztartzen neban, baina pentsa eta pentsa (ez nintzen neure antezedenteak ignoratzeko bezain kokoloa), zalantzaren harra nire poza zulotzen hasi zen. «Hauxe bi'genduan! Hainbeste kostata gero, atxaki bille hasi daittezela!».

Txapelketa osteko plazen inguruan, laster hasi nintzen zalantza okerrerantz konfirmatzen. Saioen ondoren eta batez be orduan ugariago gertatzen ziren egun osoko deietan, jente askogaz eta askotarikoagaz tratatzea gertatzen da eta, bidezko zenez, txapelketa kontuak hutsik barik azalduko ziren. Erdi olgetan-benetan, bertsozaleen artean usain txarreko banakuntza somatzen neban. Baziren bihotzez zoriontzen ninduenak, baina askoz gehiago nire lanari erreparoak aurkitzen eutsoezenak. Zeharki eta disimuluan kuestionatzen ninduenakandik zuzen eta gordin deskalifikatzen ninduenakana, bertsino posible guztiak jasoten nebazen. Beti be adierazpen karinosoen forman, ongura jatorrean, «lagunetik lagunera», baina edukiaren kontundentzian dudarik ez gelditzeko moduan. Nonor, inork haren jakituria aldarrikatu barik, bere eritxiaren «apaltasuna» (barkaidak, ni ez nauk aditua... eskolan ere ez nauk ibiliegia... badakik gure garaia nolakoa izan zan... liburuetarako astirik ez diagu izan...) erreklamatzen hasten jatzunean, (ganerako konkurrentziari delako gaiaz zeozer badakiela erakusteko baliabide oso topikoa), presta zeintekez pasada eder bat hartzera. Edanaren eta lagunarte «sanoaren» animura, buruak lainotu ahala, gogoak transparentetu egiten dira eta nahi ez zeunkeen guztiaz jabetzen zara. Hurrengo baten alkarregaz hotzean topo egin dozuenean, esango eutsun:

—Hi! Barkaidak lehengoan zorrotzegi hitz egin izana. Batzuetan zurruta lotsagabetu egiten baita!

—Ez daukazu barkamenik eskatu beharrik. Bakotxak bere gustuari jarraitu behar dio.



Zurrutak edontzitik ez daust inoz ezer esan. Beti norbaiten barrutik berba egiteko dependentzia dohakabea daroa gizajoak, baina esan daiteke berak ez dauela ezer asmatzen, fuga batzuk edegiten baino. Ahoa, zurrutagaz edo barik, bietan ari da benetan. Egiaren kontrolean dago aldea.

—Nik estimatzen haut, eh!

—Pozten naiz, baina ez daukazu ahalegindu beharrik.

—Gertatzen dena hi diferentea haizela eta gu beste era batera ohituak gaudek.

Hortxe dago diferentziaren kakoa. Beste era horretan dohai guztiak biltzen badira, (eta hori, une-unean ez bada, beste batean gogoz azaldu izango eutsuen), zure aldeak nahikoa hutsik egon behar dau. Eta halantxe, gaur hemen, bihar han, neu bila joan barik, inondik be sinestu gura ez nebana bistako egin jatan.

Zuzeneko iturrioi ez neutsen jaramonik egingo, («beti jjaozek iñon ona minddu gurekoak»), beste informatzaile askoz zehatzago eta sinesgarriago batzuk osotu ez banindue. Neuk be banebazen tokian-tokian nire txapelaz poztu zirenak bat eta bi baino gehiago. Honeik hutsik barik jakinazoko eusten euren inguruko barri. Hamaika bider esango neban:

—Ez iezadak horrelakorik konta, eguna amaitu arte bederen. Ezjakinago eta lasaiago ibiliko nauk.

—Jakin egin behar duk, ordea!

Eta xehetasun guztiakaz eta izen zehatzakaz kontatzen eusten jakin beharrekoa. Unean bertan garrantzirik ez emoten

edo barrearen arkupetik pasatzen ahalegintzen nintzen arren, asti-
ro-astiro ezin izan neban ekidin neure burua hostilitatez ingura-
turik ikustea.

—Ez zagok eskubiderik, hi! Egundoko kalapita izan genian
hire izena zela eta ez zela, batzuek baietz, beste batzuek ezetz.
Azkenean batzordearen esku utzi ziaten eta hemen baiezkook
irabazi genian.

—Horiek guztiak hor egongo al dituk bazkaritan?

—Baten batek esan zian, Amuriza ekartzen bazuten, bera
ez zela etorriko, baina gehienak hortxe egongo dituk, bai.

—Ospa egiteko motibo argia eman didak.

—Ezta pentsatu ere! Ikus dezatela eta irents dezatela.

—Bertsolaritza txokeko ekintza gisan hartu behar al diat?

—Zurrut batzuk eginda, denak jatortzen dituk. Ikusiko
duk azkenean zein giro ederra izango den.

Herri edo auzo batera joanda, lehenengo informazinoa
honelakoa hartu ezkero, frontera zoazelakoa emoten dau. Bota-
tzen eustezen izenetan, («urlia ezagutzen duk... bai, gizon!,
hau beharbada ez duk ezagutuko, baina hantxe ibiliko zaik ingu-
ruan»...), ez konturatzen eta ez gogoan hartzen ahalegindukoi
nintzen, neure defentsarako, noski, ze etsaigo ez-identifikatuak
bertan dagoela jakin arren, ez dauka badakizunaren aurpegi
zehatzik. Danak bardintsu barreka, baita txaloka be, ikusten
dozuzenean, iruditzen jatzu helerako informazinoa esagerazi-
noa zela edo, ederrago oraindio, entzuleria hostila be irabazi egin
dozula. Arpegi jakina bada, ostera, haren keinuen neurritasuna
erdeinutzat hartzen dozu, edo, beste edonor baizen amultsu agiri
bada, faltsukeria iruditukо jatzu. «Hementxe jjaozek» pentsa-
tzea artegagarri bada, «horreixek dozak» jakiteak tripak astin-
tzen dauz. Egunean bertan umoreak eta derrigorrak dana gain-
diazoten dau eta, ridikuluren bat egin ez badozu, azkenean garai-
penaren sentsazino kemengarria geratzen jatzu, baina bihamo-



nean, hurrengo egunetan, luzera, beharbada jakinki jasten ez
zaren zeure baitako geruzetan, galdera oharkabe bat azpijane-
an dabiltzu: «Zegaittik enfrenteu bi'jjoat euren etsai deklareu
enazenen aurka?».

## POSTXALBADORISMOAREN DEKADENTZIA

Bitartean OH! EUZKADI aldizkari berriaren lehen zenbakiak
honako artikulu hau argitaratu eban, HASTERA NOA GRA-
MATIKA LUZEAN izenburuz:

-----------------------------

Domingo Kanpaña hilezkor baten gisan, kritika, literatur
kritika esan nahi da, zamari geldoan dabilen animali motza da, gure-
an. Ez da noski notizi berria hauxe, eta hala adieraztea ere ez da
ausardia latza, denok baikaude ohartuak kritikak beharrezkoa duen
sorketa lanaren makalaldiaz: berez oso kuadrupedo laisterkaria ez
zena pentsu gabe gelditu. Ez hanka eta ez buru dabil, autoaren
maleteroan, komuna publikoetan, ohe azpian, guaguaren geltokian
eta edozein taberna zokotan topatzen dugula, atzaparra nesken kol-
koan edo geronen sakelean sartzen digun arrantzale arrantzagi-
lea, eguneko eta eguneroko jakiaren bila erromes karota.

Elikadura berriak bilatu behar honek zorroztu egin dio ins-
tintoa eta alor berritan barrera asi zaigu abiatzen arin, deusetan
erreparatzen ez duelarik. Hala zapaldu ditu batere kupidarik gabe,
azken bolara honetan, aza hostoak eta sinekdokeak, artadiak eta
metonimiak. Ez instintoa zorroztu bakarrik, irudimena harrotu
ere bai, eta bertsolaritza asmatu.

Oraintxe omen dugu herri bat izaten hasteko aukera, diote
politikoak ez diren ez gutxik ere. Non ezagutzen da, ordea, hero-
erik gabeko herririk? Herriek, serioek behintzat, beren kanpeonak
dituzte: konterriko zerbeza edalerik handiena, bailarako pipa tira-
tzailerik dotoreena... Lehiaketa otu zitzaien egitea. Izan ere, hama-

bi urte tarte luzeegia baita, epaiaren pruritoari atsegin egin gabe.

Horrela bakarrik uler daitezke Satrustegi euskaltzain jaun apezaren hitzak Baldan: «...gertakizun hau garrantzi gehiegikoa da...».

Bai, zein egiteko ederra den «egoki, egoki ari da gaztetxo hau» komentatzea, bernak gurutzatuta, Voltigeurs-aren kea jaurtiz. Horretarako prestatu zituzten, bilera asko eta eztabaida luzeren ondoren —hala uste dugu behintzat—era guztietako gai apropos haiek. Alde batetik, inuzente itxurako koxkadunak: «Eta ni?, dio haurrak dibortziatu nahi dutenei». «Ez dut handitu nahi, esan dizu haurrak». Bestetik, ezin ahantzizkoak, sozial gisakoak: «Emaiguzu eguneroko lana», «Biok saltzeko zaudete...». Angustianteak ere bai, amets histu bat iduri: «Hire jaiotetxea zutan zegok», «Arrantzale bat falta da lehorreratutako txalupetan: zure senarra».

Badutela denek ere beren 'zera', eh? Egon, egon, sakoneak ez ditugu aipatu eta: «Aita», «Euskal Herria», «Bihotzean min dut». Noski, entzulegoa heterogeneoa izaten da eta gaien seriotasuna nolabait konpentsatzeko, horra non epaimahaineko jaun eskuzabalek bi situazione humore jatorrezkoak asmatzen dituzten, herri xehearen alaigarri: «Neska polita eta neska itsusia», «komunera larri joan eta okupatua aurkitu duzu». Gu Satrustegirekin: gehiegikoa.

Kritika indarberritu honek asmatutako azken laisterketak, nola ez, sasoi berri bat urratzen du, bertsolaritzaren aro modernoa estrainatu omen du, osasunez. Aro berri honen izena, noski, postxalbadorismoa da. Badakizu, beraz, poesia egin zaigula nagusi eta poeta ez den edo egin ezin den (edo nahi ez duen) bersolariak jai duela. Eta bat baino gehiago akojonatu egin da, ezinbestean. Orain, edo hemendik aurrera, ez dira gauzak lehen bezala gertatuko, 'prestatu' egin behar du nork bere burua, 'entrenamendua' behar dute bersolariek, ezer eginen badute. Nola uler, bestela, bakarkako bersoetan ere doinua aldatzea? 'Entrenatu' egin behar «sentimentua nola dugun guk haize hotzeko orbela», «mihingainetikan bihotz barnera doa herriko kordela», «zer kolorezko airea



ote da gizonaren samina?»... eta antzekoak botatzeko. Ez gara gu, by jainko, irakurketa eta estudioaren etsai. Baina, juradoko jaunok, (noizko emakumeren bat? diote zenbaitek), ez ditzagun egin bersolari guztiak poeta makuludunak. Kritikak bultzatu eta bide bakartzat hartutako postxalbadorismo hau, post guztiak bezalaxe, dekadentziaren harrak joa baitator: prosaismoaren ordez transzendentzia, azkartasunaren ordez geldotasuna, ironia eta humorearen ordez seriotasuna eta asperdura. Beste hitz batzuetan, ziri eske genbiltzanoi enbor lehorra erori buru gainera, eta piperzalea zena ezkurrak bazkatzera.

Hasieran erabili dugu metafora zoomorfikoa profitatuz, Bilintxen hitzetik hortzerako ahalak eta ezinak harrotzen hasi behar ez badugu ere, gogora dezagun Amurizak «aita» gaiari botatako hiru berso diotenez kritiko jaun agurgarri bati (noizko emakumezkoren bat? diogu denok) negar egin eraziak haietan bi aldiz aitortzen duena, lehenengoan:

*Aukera eder hau izango zenik*
*ez nuen hemen espero*

Eta hirugarrenean ostera:

*Gai hau kolpera jarriko zenik*
*ia ametsa dirudi*

Bai, ongi etorri zitzaion, primeran, gaia Amurizari. Baina hori, irakurle maitea, ez da tranpa bat, examinatzera joandakoan ongienik ikasitakoa suertatzea bezala da, suertea eta entrenamendua. Eta hau bai garrantzizkoa dela lehiaketa batetara azaltzen denarentzat. Hori da Amurizak erakutsi duena: bertsolaritza «ikasi» ere egin litekeela. Hori da ikusi ez dutena eta hala gelditu dira, proteinak asmatutako munduan baba jaten. Beti esan ohi dugu lehiaketak kalterako direla. Egotea zuten presentatu gabe.

Mando gaineko kritikaren arrazoinak ustelak direla gaude. Baina azken bolada honetan hartu duen indarrari erreparatuta,

beldur gara ez ote gauden dagoeneko bersolaritza monolitiko eta akonplejatuaren aroan. Ojala ez.

------------------------

Artikuluak ez dakar sinatzailerik (apaltasuna?), baina aldizkariaren kontrazalean dio: «Ale honen egileak: Jokin Ansorena, Gotzon Egia, Ramon Etxezarreta, Koldo Izagirre, Andu Lertxundi, Josetxo Lizartza, Joxan Muñoz, Lurdes Oñederra, Ramon Saizarbitoria, Ibon Sarasola, Arantxa Urretavizcaya. Maketa eta marrazkiak: Juanba Berasategi». Artikulu anonimoa izanik, honeitariko baten batek izan behar ebala pentsatu behar zen. Arantxa Urretavizcayak alkarrizketa bat egin barri eustan ERE aldizkarirako. Gogoan daukat zelan etorri zen orduan lan egiten neban Bilboko EGINen bulegora eta berbetaldi luzea eta lasaia egin genduen. Alkarrizketa ona eta tonu karinosoan izan zelakoa daukat, itaun eta intentzino mingar barik. Gatx ikusten neban Arantxa Urretavizcaya izatea beste artikulu gibelerre honen egilea. Beraz, besteren batek izan behar eban. Denpora aratinak (zetako behar dau korritu, geldi egonda harrapatzen bagaitu?) mundu txiki hau arin menperatzen dau eta laster jakin neban Koldo Izagirre eta Ramon Etxezarreta izan zirela egileak.

Postxalbadorismoa. Dekadentzia. Nire txapelaren deskalifikazino kultista honek artikulua baino gehiago libelo difamatzailea zirudien. Ez dakit bertsolari bati buruzko maiseo bat zetatik izan zeitekeen hain garrantzitsua, «Manifestu Komunista»ren imitazinoz-edo, bikotean egiteko, edo hain arriskutsua, izenak ezkutatzeko. Mingostasunean behintzat ez zegoen disimulurik. Ezta ignorantzian be. Frogatzat aitatzen dabezen esaldi biei («aukera eder hau izango zenik ez nuen hemen espero» eta «gai hau kolpera jarriko zenik ia ametsa dirudi») halako alkantzua somatzen dautsenak ez dabiz Domingo Kanpañaren mandopetik urrun. Bertsolaritzara hurreratu den edozein txorikunek daki bat-bateko bertsoaren lehen puntuak gehienean «betelana» direla. Pasaerako esaldietatik, non pentsamena azken puntuen arduran dabilen, horren



ondorio potoloak etaraten dabezenei ez naz harritzen gero, ahapaldiaren benetako intentzinoak datozenean, «enborra buru gainean» iruditzea. Eta apurtu ez enborra! Beste aipamenak be («sentimentua nola dugun guk haize hotzeko orbela», «mihingainetikan bihotz barnera doa herriko kordela», «zer kolorezko airea ote da gizonaren samina?») betelanekoak dira eta, gaurtik begituta, ez nabe bape lotsatzen, betegarri topikoen lekuan sentsazino diferenteak daragiezen aldetik. Gure kritikari talentosoei hainbeste txokatzeko, «bete-lana» ez zen behintzat «alper-lana» izan.

Artikulu honetatik eta bideko hainbat informatzailegandik, laster usnatu neban, eta mingarriro baitetsi, modernitateaz presumitzen eban euskal intelligentsia probintzianoan lagun gitxi izango nebala. Izagirrek eta Etxezarretak, jakinean edo kointzidentziaz, euren sentikera partikularraz haragoko begigo bat formalizatu eben. Jente luma-zorrotz hori nekez aurkituko dozu bertso saio arruntetan, eurek «autentikotzat» definituko leukiezen zelaietan, lagunarte, bertso afari eta abar. Nekez hurbilduko jatzuz (nire parean ez dakit inoz gertatu diren), pentsatuz: «Bertsolariak hurretik ezagutu behar ditiat, txapelketen edo jaialdien paraferlnaliaz bestelako giro lau eta naturalean». Hori nekez egingo dabe, baina ez dira horregaitik, ezagutza hurbil eta dibertsoaren lanetik libratzen dauen ustezko argitasun eroso eta bistosoari esker, eritxia dominatzeko gaitasun barik sentituko. Fauna horretan ez neban abegirik lortu eta ez parkatzea erabagi eben.

## JAIOTERRIKO BOIKOTA

Gertaera lokala eta, beraz, mugatuagoa izan arren, neure jaioterriko erreakzino bat ez zen beste guztia baino gitxiago mingarri izan. Ni orduan Amorebieta-Etxanoko zinegotzi nintzen HBtik, lehenengo legealdian. Herritar bat Euskal Herriko txapeldun gertaturik, bidezko zen ospakizunen bat antolatzea. Horretan zihar-

duen eta ezin neutson jaiari uko egin, neuk horrelako trantzeak gogoko ez dodazen arren. Baina baita banenkien (zelan ez dozu, ba, zeure herriko barri jakingo) jente bat kinka deserosoan aurkitzen zela, bape pozgarri ez jaken konpromiso bat ezin saihestuz. Hatan behin, Zornotzako udaletxeko gela batean nonortzukaz nengoela, Ina Etxebarria, orduan alderdi jeltzalearen bozlari egiten ebana, sartzen da eta dinost:

—Zu! Egijje da Alderdi Egun batera ez zintzakezela kantetan joango esan dozule?

—Esan dot, bai. Harritzekoa da? Alderdi Egun batera zelan joango naz, ba, neu HBkoa izanda?

—Ederto! Horixe baieztu gure gendun.

Aurkitu eben atxakia! Alkarrizketa batean, beste hamaika gauzaren artean, kazetariak itaunduko eustan ea Alderdi Egun batean kantatuko neukeen eta nik ezetz erantzungo neutson. Ekitaldi politiko espezifiko eta alderdikoi batean kantatzekotan, neure aukera neukala eta, zirkunstantzia normaletan, hortxe bakarrik kantatuko nebala. Pellokeriarik bidezkoena begitantzen jat; inor harritu eta gitxiago mindu behar ez leukeena. Arzallusek HBko mitinean ez dauela hitzegingo irakurtea ez neuke inondik be iraintzat hartuko. Baiezko gertutasuna erakutsi baneu, nork deitu behar eustan Alderdi Egunera, HBko kargu bat izanik? Inork sekula egingo ez eustan dei baten ukoa inbokaturik, PNVek boikota egitea erabagi eban. Zornotzako Zelaieta zineman Azpillagaz beste finalista guztiakaz jaialdi arrakastatsu bat eginik, «El Cojo» jatetxean izan zen herri bazkaria. Hurrengo egun batean, inoz egin dodan Semaforo Gorri erderazko bakarrean, «Las tripas de un boicot» izeneko artikulua idatzi neban.

Auzia zentzun barik politizatu zela eta horri ez jakola liskar politikoaz haragoko deribazinorik ikusi behar dinoenek neurri bateraino arrazoi daben arren, baita egia da, beste neurri nahi bada txikiago baina mingarriagoan, norbere herriko gorabeherek oso gune pertsonala joten dabela. Boikotak azken batez konfrontazinoaren berotasuna dakar eta horrek norbera be neurri batean gailendu egin daike, baina ez da holan, nire kasuon behintzat. Gure herrian, neure jaioterrian, nire txapelak askori min emon eutson eta beste asko ez ziren lar poztu. Herkide baten garaipenean atsegindu beharrean, erremindu egin ziren, batzuk burua bueltatzeraino (zorionak emon beharrik ez eukitzearren), eta beste batzuk defentsiba destainatian. Beti egoten dira inoren onak txistua mingosten dautsen triperreak, edo gauzarik ezbardinenak politikagaz nahasten dabezen lealista kamutsak. Salbuespenak, direnik ugarienean be, arauan sartzen dira, baina Zornotzako salbuespena orokorregia izan zen. Inori erasotzeko ezelako asmo barik, norbere burua estutzea besterik ez dakarren jardun batean, norbere jaioterriko sektore handi zabal eta ustez neutral batek hain mingots erantzutea oso tristea izan zen niretzat. «Ez eijjok horreri erain! Herrijjetan badakik batzutan zelako erreaziño ziztriñek eta ulergatxak gertetan dien». Badakit, banenkien, baina ulergatxak ez ezik, guztiz ulergarriak izanda be, auzia ez da bape aldatzen. Ulermenak turbazino bat argitu leike, baina ez minberatasunik arindu.



## Errefuxiatuen artean be

Azkenik, beste datu bat aitatuko dot, berariaz goibeldu nindueana. Baneban anaia bat errefuxiaturik eta urtean zehar, ha bisitatzera edo beste zenbait motibo bide, nahikoa sarri izaten nintzen Iparraldean, ondino errefuxiatuak zabal eta lasai samar zebizenean. Txapelketa osteko joanetorrietan ez dago esan beharrik berbakizun nagusietako bat zein izango zen. Errefuxiatu euskaldunengan, gehienak bertsozale edo bertsolaritza estimatzen ebenak izanik, susmatu neban, eta apurka-apurka konfirmatu, nik irabazteak ez ebala entusiasmo handirik sortu. Arestian azaldu-

tako bertsozale eta intelektual munduko erreakzino bardintsua errepikatu zen kolektibo honetan be. Batzuk asko poztu ziren, jakina, baina beste askok, hurbiltasun politikotik itxaron zeitekeenaz bestera, muzinti eta atxakiz beterik hartu eben nire txapela. «Irabazi nian eta hor konpon!», hots egingo neban, zelanbait erabagitearren, txapelketa osteko erreakzinoak orokorki komentatatzean, eta ondoren behin baino gehiagotan entzun behar izan neban:

—Hi! Ba, ez uste hemen ere hik irabaztea gehiegi gustatu denik!

—Orduen, non poztu'ozak nik irebaztiaz, —pentsetan neban —, errefuxiatuen artien be gustoko ixen ezpada?

Kanporantz agertzen neban gailentasuna barrurantz barrdin sentitzen ahalegintzen nintzen, baina astiro-astiro zauria erremedio barik zolduz zihoan.

Honegaz guztiaz ez dot esan gura sinpatiarik jaso ez nebanik. Kontua ez da aldekorik bai ala ez, auzia alde ala kontra paratzea baino. Nik ez neban behar, eta ez neban itxaroten be, ezelako atxikimentu gartsurik. Txapelketa batean ez da jokatzen inongo mundurik ez inoren izaterik. Soil-soilik uste neban, edo ilusino horregaz itzuli nintzen, txapelak autormen eta karino orokor bat ekarriko eustala, bertsolari lez ibilteko, besterik ezebez. Erronkara jota, neuk be banenkien oilartzen, baina sakonean, neure kautako isilean, ezin neban eho txapelketa ondoren, jente askoren begirako, aurretik baino okerrago geratu izana. Nenkiena ahalik ondoen egitera joan nintzen eta ustez lortu be egin neban. Ohartzen nintzen zenbait arlotan (euskera batua eta abar) ohiko bertsolaritzaz beste ezaugarri batzuk agertuko zirela, baina neure ingenuitatean uste neban hori guztia estimatua izango zela, zenbaiten artean halan gertatu zenez. Inondik be ez neban itxaroten hain itsaski bihurri eta agresiborik. Bertsolariari —eta uste dot beste edozein jente aurreko iharduleri—guztiz beharrezko jako publikoaren jarrera minimoki karinosoa, bere lana motibapen apur bategaz egingo badau. Bestela be bada bildurtzeko nahikoa motibo, entzuleen begirada uzkurrekin topo egin barik. Niretzat —eta norentzat ez?—animoso aurkitzea nahitaezko da, lan bistosoa egiteko. Horretarako entzuleakan harrera baikorra, xerakorra, txarrean animatzaile eta onean eskertsua, igarri behar da, igarri egiten baita. Alderantzizko sentsazinoak larritu eta estekatu egiten nau. Ez dot behar nitaz maitemin daitezen, baina ezin dot bizi posibilitate horren xarma barik.



Abadetza nostalgiaz gogoratzen neban. Nire bizitzako arorik ederrenetakotzat jo behar den hiru urte eta erdiko ibilbide aktibo laburrean, (espetxeko zazpirak pasibo luzean sartu behar dira), ni eta nire antzeko asko oso maitatuak izan ginen geure inguruan. Etsaiak bagenduzen, ez gitxi, bai indar agintari eta errepresibo frankistetan, bai honein euskarri aldeko edo bildurpeko sektoretan. Gure mezua eta biziera, eleizan zein gizartean, barria eta txokantea zen, baita konpromisozkoa be, argi baitzegoen espetxegai ginela. Halan be, guk beragaz tratu zuzena genduen herriak (oso herri zabala, geure ardurapeko barrutietatik urrun mogitzen baikinen) karino handia euskun. Orduko abade «errebeldeak», geure eremuan, oso popularrak ginen, baina batez be oso estimatuak. Sentsazino horixe da iraganak itzi daustan hondarrik samurrenetarikoa. Bertsolaritzan antzeko paralelismoa itxaroten neban inozoki, herri bertsozalea eta abadetzako ha gizajente beratsua zelakoan. Halan be, (eta oraingoan, konparazino hertsiki doia izan daiten, eremu bat eta bakarrera mugatuko naz), konturatu nintzen abade lez maite izan ninduenek bertsolari lez musturra okertzen eustela eta askok pena hartu ebala, txapeldun urten nebalako.

Abiada kementsu eta tolesbakoan zihoala, zugatz bat zapla trabestu jakon zaldia aurrerantzean nekez oldartuko da lehengo jareintasun fidatuan, tente ikusten dauen guztia bere zain iruditzen baijako, biderdian etzuteko. Zelai lau eta soilak be ez dautso bildurrik garbituko, aitzitik gehiago larrituko, seinale bako

mehatxuak ez baitau txoke jakinik abisatzen. Horrelako zeozertsu nabari neban neure kautan, izugarrizko desengainuaren barruan. Ezin neban asimilatu zergaitik saio bakotxa erronkatzat hartu behar neban, konfrontazinotzat ez bazen. Burruka politikoak, adibidez, denik agresiboena bada be, ez zaitu zeure aldekoak ez direnen lagunartera behartzen. Gehienean alkar ikusi barik garatzen da gudua, zelaitik zelaira edo bulegotik bulegora, eta bakotxa bere kideakazko harmonian mogitzen da. Distantziako etsaigoak ez dau sentimenik hainbeste zauritzen. Bertsolariak, ostera, jente mota guztien artean ibili behar dau, danakaz tratatu behar dau, oso harremon zuzen eta pertsonalean. Hurtasun horretan, begiko ez zaituela susmatzen dozunakaz lagun giroan tratatu beharrak («oso jatorrak zarete» eta abar) ondoeza sortzen dau. Pentsatzen neban: «Zegaittik ibilli bi'jjoat ni maittetzeko asmorik eztekienak seduzitzen? Neu etsai deklareu enaijjakenak konkistetan?». Kemenak, derrigorra denean, unerik gogorrenak gaindiarazo daikez, baina bertsolaritza lako «kirol» bat kemen mailan planteatu beharra, independentziaren baten gerra bailitzan, triste eta gogor egiten jatan.

## HART'IXUE POPATIK

Egunak hogeta lau ordu daukaz eta erdiak gauarenak, sarritan loaren ordez zeure abiadura mentalean setiatzen zaituen dama horrenak. Egunaren ordu ugarietan eta astearen egun ezbardinetan, izango ditut, bai, kemen aldiak, baina maizago (eta luzeago) makurraldiak, eta ez gitxitan hondoaldi akabatuak. Astiro-astiro, laubost hilabetetan, begien luze-zabaleko zelaia esfinge menperagatx bat bihurtu jatan, eboluzionatzeko aukerarik be izten ez eustana, zeinaren jauntasun harrizkoa irribarre xumerantz errenditu ezinaren patuko ikusten neban neure burua, eta ez ebala merezi iruditu jatan. «Hart'ixue popatik!». Bertsolaritza lagatzea erabagi neban. Hitza emondako konpromisoak beteko nebazen, baina dei barriei ezetz esaten hasi nintzen, arrazoirik argitu barik ondino. Ezin nebala eta kitu. Saio terminal hareik, kanporantz ezer islatzen ez baeben be, apoteosikoak ziren nire baitan. Bertsolaritzaren ritualismo eta erlazino mundu guztiaren ganetik ikusten neban neure burua, zeina lehentxoago marrazo bat kaian sarepean lez irudikatzen neban, umeek haren izugarritasunari harrikada inpuneak eta handiek begirada oraindio desizutu bakoak jaurtitzen eutsoezela.

Marrazoarentzat sare ganean be ez dago espektatiba handirik eta gurago dot arranoaren aireko irudia, urpekoak bildurtu egiten bainau. Ez dakit uger. Txapelduntzat autortu zein ez, bizi guztirako bertsolaritzat uste ninduen entzuleria begirada horizontalean korrituz, pentsetan neban: «Bazenkijje nire pentsamentuen barri!». Danbateko zirrarak nabaritzen nebazen, posibilitate horren egiak irudimena traspasatzen ebanean, baina irudimenean gertatzen diren aktualizazino errealak hain instantekoak dira, ezen atoan itzultzen nintzen barnetasun inbulnerablearen gozamenera. Instant erreal hareitan entzuleak txistuka eta marruka ikusten nebazen, Carrerorena kantatzen lez, eta bertsolari lagunen begietan nire kontra txokatzera zetozen meteoritoak. «Hi zoratuta hago! Txapela irabazi eta bertsolaritza utzi?». Instant horreik luzatzea zorotasunaren erreinuren bat zeharkatzea izango da.

Honelako hamaika pentsakizun eginda, bueltan etxerantz nentorrela, goizalde beranduan gehienik, neure Dyane kulunkarian ezin nintzen kabitu eta edozein ikuspegi zabaletan geratu eta bide baztarrera urtengo neban, alde bietako ateak zabalik itzita, infinituak leku gehiago euki zegien. Egunez mugek ez dabe izten infinitua irudikatzen, baina gauez bertan zagoz eta zure pentsamentu eskandaloso bat espazioan erabat aske eta detektagatx nabigatzen ikusten dozunean, ahalguztiaren hegal bat joten dozu, beste zenbat eukiko dituen ez badakizu be. Egunak arin,

konpromisoak amaituz eta agenda hutsik geratuz zihoan. Geroz gehiago kostatzen jatan okupaturik nengoela justifikatzea eta azkenean iritsi zen etorri behar ebala benenkien kinka. Inguruka ibili barik, bertsolaritza itzi egiten nebala iragarri behar zen. Zelan? Deitzaileei garbi esaten hasita, horrela barria astiro-astiro zabalduz joan zeiten? Semaforo Gorri baten bitartez danba, zurrumurru bihurrien bazka bihurtu barik? Behar zen, baina ez nintzen ausartzen!

Beharbada samurrago izan zeitekeen urtebeteko etenaldia iragartea. Laster ezkontzeko nenbilen, bidaia bat aduzi nezakeen, baita egin be, behar bazen, eta azken batez «motibo pertsonalentzat» jentea beti dago ulerkor, errukirako ez bada, paternalismorako aukera bat emoten dautsozulako. Baina bertsolaritza iztera zoazela jakiteak haren urgulua mindu leike, erabagi amankomun bat unilateralki hartu dozulako. Hemen norbere ahultasunen erakusketa oso bisitatua da, baina besteakazko desadeia ez dautsue pasiboki onartuko. Etenaldiari lorrina eritxi neutson. Hoba zen barria astebetean amaitu eta kitu. Hemen iraganak laster ehorzten dau bere burua. Okerrena da hari pendienteak iztea, zeintzuetatik lurpean zagozela be tiratzen dautsuen, ez osasuntsu biztu gura zaituelako, zure aukera ustez zoriontsuagoa perturbatzeko baino.

Barria osoan eta zapla emotea aisa erabagi neban, baina erabagiaren betetzea luzatu egiten zen. «Hurrengo Semaforoan». Idazten be hasiko nintzen, baina hirulau lerro orduko, bertan behera itziko neban, papera birrintzea ahaztu barik, (orduan idazmakinan lan egiten genduen), ezein aztarrenek ez zegistan aurrerik har. Egunak joan ahala, adorea kontrabidean zetorren. Topo egiten genduen, «nora hoa?» esaten eustan, «heu nora hator?» itauntzen neutson, eta erantzun barik, keinu etsi batez atzerantz kurutzatzen jatan, bidearen norabidean neure begirada hutsagaz izten ninduela. Heurt egiten neban eta geriza tente eta txairoki jantzi bat zirudiena beheko bihurgunean ostentzen zen. Itxura zarpaila agertu baleu, berehalako sinpatiaz identifikatuko nintzakon, baina



elegantzia harek, ia gorputzez jantzia emoterainokoak, aztoratu egin ninduen, izaki influiente bat izan zeitekeela-ta. Badaezpadan neure geriza bilatzen neban lurrean, baina hau be beti bueltako norabidean aurkitzen neban. Bidea desibili eta aranean animoso batzen ginen barriro alkarrengana, baita gogotsu abiatu be erabagirantz, baina kota batetik harago, oxigenoa urritzen edo pisua arintzen zelako, gorputzetik despege bat lakoa sentitzen neban, atzean ezgaitasun bakarti bat itzi ebana, ninduena. Fenomenoan situatu arte, geratu egingo nintzen eta beti bihurgune berberetik beherantz agertuko zen adorea, gorantz zereginik ez zegoen plantan. Alperreko saiatze gero eta desfidatuagoen segidan, (egunean baino egunean beherago geratzen nintzen), inoz ez nintzela ausartuko sinestu neban eta, halan izatekotan, zetako jardun derrota jakinak metatzen, araneko ibileran zentratu beharrean?

## AUSARDIARIK EZ

Ez nintzen ausartu! Horri, arpegira begiratuta, koldarkeria deritxo eta hementxe hasi zen nire barruko iskanbila bandoanitza. Zaldiak edo lasterkariak urtekerako danbadaren zain lez, bazirudien inpultso danak egon zirela erabagiaren anulazino zain, bakotxa edonorantz oldartzeko. Ez zen halakorik gertatzen jatan lehenengoa, nahizta beharbada handienetakoa, eta banenkien metodologia. Itzi indar asaldatuei (batzuk amorruz, beste batzuk apalduraz, asko komediante soilak, nahastearen inkontrolaz baliatu zaleak) nahi daben lekurantz asaskatzen, neka daitezela alkar ezin apartatzen, handitu daitezela alkar jotzen, eta akidurak entzuten hasteko moduko jausmenera errendi dagizenean, orduan hasiko gara berbetan, neuk be atseden hartu ondoren. Eguneko harremonik dibertsoenetan, umeakaz jolastetik goardia zibilagaz enfrentatzeraino, iskanbila hori guztia aldean eroateak, ontzi soil gisan bada be, akabatuta izten zaitu. Ontzia ez apurtzeko segurantza egin-

da dago, barne matxinoek ez baitabe kanporako ezelako interesik erakusten. Euren artean etsaigo hilgarrienak badaukez be, danak bat datoz dema guztiak barne zelaian jokatu behar direla. Kanporantz ez da barre zabal bat besterik agiri, edo beharbada irribarre makurbera bat, gehienik be tristura kutsu bat dariona, aire xarmagarriagoa erantsiz, baina susmo orotatik libre, horretarako barne mogida guztia hauteman beharko bailitzateke, eta hori ez da inoz gertatuko. Lasai, beraz. Denpora, ezer ez izanez ganera, kasu honetan alde dator. Zergaitik irudikatu behar dogu beti joaten eta ez etorten? Piztiak eta hezlea amorean dagoz. Alkar konbentzitzen ez badabe be, apur batean ez jake erasorako adorerik egingo. Hortxe baitago kakoa. Zergaitik huts egin daust adoreak? Zergaitik naz honen koldarra? Baina hau erabagita dago, baita ordainduta be.

Orain auzia da ea ausardiaren makalak ala arrazoien sendoak bueltatu nauen, baina, arrazoi sendoak baziren, gatx okerragoan ibili naz, adimen eskasian alegia, zeinak, argitasun ertain bat eukitzera, abisatu behar eban bidaia bueltabakoan abiatzeko baino arrazoi indartsuagoak zegozela. Beraz, arrazoi arinak suposatu behar dira, baina holan be ez da ulertzen honenbesteko iskanbilarik eta are gitxiago erabagian atzera egiterik. Bertsolaritza iztearen aurkako arrazoiak sendoak zirela autortzeak ez nau kontradikzinotik salbatzen, baina bai rektifikazinoan laguntzen, eta orain horretan nabil. Itziok iraganari bere lotsariak ezkuta dagizen. Zer irabazten dok honeik ekarrita, denpora bertan iztekotan? Laga, laga!

Errez esaten da hori, baina bai. Demogun itxi dodala. Eta orain zer? Rektifikatu dot, baina ez konbikzinoz, bortxaz baino. Hau al da danek zeozer badela uste daben gizonaren paraderoa? Urkatzea merezi dok, baina lasai. Erabagi txikiagoa betetzeko adorerik euki ez badok, hori be apenas egingo doken. «Ez eijjuek arbolai alperrik begittu». To! Geldi hortxe! Nik arbolei liluragaitik begitzen dautset, neure kolega maiteak direlako. Kolegak ala maiteak? Maiteak! Maiteak! Ba, habil kontuz, maitasunak maiz deitzen baitautso sokari. Baina ez dok hori egingo. Soil-soilik, lotsagarria haz.



Oh! Hortxe izorratzen zaituet. Lotsa besteren begietan bakarrik gauzatzen da. Artean jolas pribatua besterik ez da, txikia denean, eta, handia denean, emozino itzel bat, hain eztanda aparatosoaren gordagi inpenetrablea zarela sentitzean. Eguneroko arrunkeriak transfiguraturik agiri jatzuz. «Kaixo! Zelan?... Egun ederra, ezta?... Biherrerako gogoz?... Bai, euzkijje be badator-da». Solaskide inozenteari bekoz beko begitzen dautsozu eta zure irribarrea beraganako adeitzat hartzen dau, izatez haren begietan zure eztandaren lorratzik ez dela nabari ikustearen ironia besterik ez denean. Urrunago bazagoz, beharbada galdetuko dautsue: «Zer berri Bizkai aldean?». Eta, betiko topikoekin erantzunez, pentsatzen dozu: «Ah, gixajook! Eztakixue ondo Bizkai aldien ze barri pasetan ari den zeuen musturretan, baia jarraitt'ixue zeuen zorijjonien, neure bakartasun oroahaltsuen kontzientzijje emoten». Zelan haiteke (orain hitaz ari nok), heuk ez dakiala, eta ez dakialako, honelako gozamenaren emoile izan?

Lotsa besteren begietan gauzatzen dela ondo konprobaturik esan dot. Begirada zuzen bati eusteko baino koldarrago nazelarik, egun hareitan beren-beregi saiatzen nintzen neure indemnitatea aurreko ninietako inexistentzian hautematen, batez be solaskide emea zenean. Orduan honek nik bilatzen nebana baino gehiagoren inpresinoa har zeikeen, suposatzen baita, ez dakit zergaitik, begirada insistenteak, beste begirada bategaz neurtzen denean, helmugaz harago joten dauela beti, eta halan batzutan ikaratzen nintzen, maiteminen baten pentsamentua gauzatzen ari ete zen, bardin dautso zein norabidetan. Berak, nire finkotasunean, amodio baten gonbita uler zeikeen eta suposamen horretatik has zeitekeen jokuari zelaia emoten eta, aurreregi joaten deskuidatzen banintzen, suposamenagaz bat zetozen xehetasun batzuk, batzutan bilakaeran loditzen zirenak, eskeini beharra zegoen, dana ekiboko doilor bat izan zela deskubritzearen mina ekiditeko. Ez gagoz maitatzera behartuak, baina bai ez defraudatzera.

Edo soil-soilik neure beraganako maitemin jaiokortzat uler

zeikeen eta, nahizta berak zuntz beretik erantzuteko asmorik ez izan, inorentzat ez dago sobran maitemingarri dela ikustea, (ez ahaztu alkarren begietara begira gagozela), epe luzera maitasuna baino salbagarriago baita maitagarri sentitzea. Orduan berak be, neuk alderantzizko suposamenean lez, etorkortasun bardina erakusteko beste bihotz euki daikeenez, bide berberetik abia geintekez eta hasieran, ez batarengan ez bestearengan, bideari suposatzen jakon intentzinorik egon ez arren, (niregan ez behintzat), bideak berak senti daike eskatu bako sentimentuen askatasuna eta orduantxe da sintzeritateak gainpasa ez zagizen unea. Bertute honek, bere apologistek, komunikazino gardenaren sofisman, (nork esan dau ardao onak transparentea izan behar dauela?) sinestuazo gura dabenaz bestera, edertasun handiak eta asko apurtu ditu. «Hire kantatzeko posea gustatzen zaidak». Edo: «Onena haiz!». Orduan autortzen dautsozu: «Gajoa! Gehiago ez dun nire poserik ikusiko». Deskuidatu zarenaz batera, haren begietan garbi-garbi dakusu zeure lotsaren forma. Harriduraren ondoren, zu animatzen hasten da, bere emetasunaren baliabide guztiakaz eta zuk ezetz, erabagi bueltabakoa dela. Eta gero ohartzen zara zuk ulertutako maiteminik ez dagoela, zure ustezko sentimentu bat ez zapuztearren jarraitu dautsola jokuari, gustora noski, baina haragoko pretentsino barik. Hak berreskuratu dau bere posizinoa, baina zuk zelan bildu behar dozu haren begiek islatzen daben zure lotsa?

Zorionez, ezinezko deskoidua zen. Azkenean, prebisino normalean apalkizun zaurgarri izan behar ebana ibilera arrunten liluratzaile gertatu zen, barne eztandaren uhin hedakorrak kanpo espazioa astintzen baiteban, bere jatorriaren susmo izpirik translúzitu barik. Abentura zentzunbakoa, baina edarra. Ipuina amaitu da. Barriro lehenean naz, orain eskapurik ez dagoela jakitearen desabantailan, baina abantailatzat hartzeko moduan, saialdian huts eginak alperreko intentzinoen arranguratik libratuko bainau. Lehenean, baina bertanago. Alegia, segiogun izorramentuari, bertsolaritza masokismoaren formetariko bat dela asumiturik.



Bertsolaritzan jarraitzeko (edo izteko erabagia ez betetzeko) eragile nagusia koldarkeria izan zela autorturik, (orain autormenaren lotsatik inori begietara zuzen ez begiratzeak libratuko nau), uste dot bazirela arrazoi lagungarri batzuk. Txarrenetik baina behinenetik hasiko naz, gehienek azken eta ahapean aitatzen dabena bera. Niretzat bizipidea, gordinki dirua esaten jakona, eragile nagusietako bat izan da bertsolaritzan. Nire bizimodua ez da bilakatu dirua ardura nagusietako bat ez izateko moduan. Hileta joteko motibo zorrotzik ez daukat, baina batzutan neure plan ruinosoak, beste batzutan neure errakuntzak (bizi guztian amaitu ezineko etxe bat, adibidez), beste batzutan neure bildur arkaikoak bide direla, diruari umezaro urri haretako benerazino bardintsua izaten jarraitzen dot. Bildurrak direla-ta, behin burua proiektuz ganezka darabilen horreitako bati entzun neutson berak zenbat eta zor handiagoak, hainbat eta nasaiago egiten ebala lo. Sinestu egin neutson, barrua dardaratu eustan baina. Niretzat, bildurren rankinean, ordaindu ezina etor daitekizun zorrak bigarren postuan dagoz. Lehenengoan goardia zibilak jarraitzen dau. Bildur honetatik ondino ez nau loak libratu eta bildur naz heriotzak be ez ete nauen egingo.

Larogeiko txapelketa ondoren, ez neukan ezelako diru arazorik. EGINen lan egiten neban eta bertsolaritzatik gainsari mardula etaraten neban. Baina EGIN ez zen orduan (ez dakit sekula izan den) lantegi segurra, beti noz jausiko, eta ganera kazetaritza ez neban bape gogoko. Han sartu nintzen, lan batek tiratuta baino areago proiektu bati sakatzearren, baina argi neukan kazetaritzatik alde egin behar nebala. Nora? Niretzat lanpostu itxurazko bat oso zail ikusiz ganera, (ez daukat ezein adarretako ezein titulu), neure burua lanordu finkoetatik aske edo erdi aske gura neban, gogoan neukazen gurari eta asmoei ekiteko. Gero asmo asko batzuk ezinezko eta beste batzuk ruinoso gertatuko baziren be, ezin neban neure burua ahalbide horreitaz bagetua ikusi. Eta hara non, nik gura neban bizimodu klaserako, bertso-

laritza berebiziko amabitxia zela. Alde batetik diru iturri garrantzitsua neban, beste edozein lanbide zein ekinbidetan menturatzeko euskarri ona, eta bestetik bertsolaritza bera be definizinoz lanbide informala da, disziplina finkora behartzen ez dauena. Neure adimena baino barruragoko nonork haserre puntuan jaulkitzen eustan: «Nora hoa hi, mauka hau itxitte?». Bizitzari buruzko nire sentikeran oso erroturik zegoen kostata eskuraturiko on bati jareiten dautsonak zorigatxari deitzen dautsola. Badakit gizarte lehiatiaren balioetan ausardia konplexubagea garaileen ezaugarritzat joten dena, baina nire anbizinoa ez zebilen eredu kanibalkoietan. Dagoeneko ez nintzen idealismo hasberri bat, berrogei urteko ilusino zaildu bat baino. Oherakoan, mesanotxeko kajoitxoan hain panpox agertzen ziren milakoak kontatzen nebazela, (hantxe pilatzen ziren hilean behin bankura edo nonora ezkutatu arte), ni baino barruragoko ahotsak burla egingo eustan: «Nok ekarri bi'hue hiriloa, mesanotxeko berdetxuon karino barik?».

Beste arrazoi on bat bertsolaritza bera zen. Bat-bateko jardunetik at, hainbat lan eta gogoeta egina eta egitekoa nintzen bertsolaritzaz. Musikariakaz herriz herriko bertso jarrien emonaldiekin be orduantxe nenbilen gorenean. Baldintza zailetan eta medioen estimu handi barik bazen be, entzuleek maite eben eta batez be neuk maite neban. «Hitzaren Kirol Nazionala» eta «Hiztegi Errimatua» laster argitaratuko ziren. Eta nire buruan zebilzen beste amets edo ameskeria guztiak. Egia da, hau denau aurrera eroateko, bat-bateko bertsolaritza ez zela nahitaezko, baina osotasunean galdu egingo neban eta izandako hainbat gozamen eder izan zeitekezenen ukoan deuseztuko ziren, bat-batekoaren lilura ez baitago ezegaz ordezterik. Sinesten ahalegintzen nintzen —eta oso probablea zen halan gertatzea— etorriko zirela lasaitasun handiagoko garaiak, non gozamena tentsinoari nagusituko jakon, non etsaigoak ematuko ziren, edo non gitxienez neuk be muzin egiten ikasiko neban, aldeko eritxiei bakarrik jaramon eginez.

Bertsolaritzak, bestalde, bizitza guztian gehienetarik sentiberatzen ninduen medioan garatzeko ahalbide direktoa eskeintzen eustan. Medio hunkigarri eta desiratu hori euskera zen eta da, inozoki harturik, ebasio bat izan daitekeena, baina osoan heldurik, «gure aitaren etxea» oinordeko pribilegiatu lez biziazoten dautsuna. Nire lan edo lanbide gehienak euskeraren inguruan gauzatuko ziren, baina gure aitaren etxea euskerak ez ezik, euskaldunek osatzen eben, eurok batez be. Harremon anizkotx eta ezin ugariago hori bertsolaritzak segurtatzen eustan. Pentsatzen hasita, ez neban aurkitzen euskaldunakaz eta hain askotarikoakaz bertsolariak beste trata zeikeen ofiziorik.



Batzutan nire izate harroxkoa barregarri ikusten neban. Beste dohai batzuk izan banitu, edo neukazenak umetatik garatzen lagundu izan baleuste, segurrenik bertsolariz beste edozer izango nintzen, musikaria adibidez. Idatzi norbaitentzat idazten dot, bertsoak norbaitentzat kantatzen dodaz, egiten dodazen gauza guztietan ezin dot neure burua imajinatu norbait begira ez dagoela edo egon daiten desio barik. Musika da bakarra, neure burua hatan bakarrik dohatsu ikusten dodana, inorganako erreferentzia bako bakartasun totalean. Pianojole on bat izan banintz, bizitzeko inorentzat jo beharko neukeen eta horrek bere emozinoak izango ditu, baina gozatzeko, zenbat eta bakarrago pianoaren aurrean, are barrurago galduko nintzen bertan. Bachen «Toccata eta Fuga» edo Händelen «Alleluya» mila bider joa baneban, mila eta batgarrenean gehiago zirraratuko nintzen, musika joaldi bakotxean osorik berjaiotzen baita, lehenengoz entzun zenean letxe. Liburu bat zenbat aldiz irakur daikezu buruz ikasi barik? Behin buruz ikasitakoan, zenbat goza daikezu, zer datorren aurrez jakinik? Baleiteke poema eder bat inorentzat errezitatzen edo antzezten sekula ez gogaitzea, baina zeure buruarentzat bakarrik zenbat bider egingo zeunke? Musika, ostera, zenbat eta buruzago jakin, hainbat eta irrikazago desiratzen dozu, eta hots hareik guztiek zeure hatzetatik urteten badabe, amaibako jaiotza sonoroan bizi zara.

Beharbada arte plastikoetan zerbait antzekoa gerta dai-

teke artista sortzailearen baitan, baina behin koadrua egindakoan, kontenplazinoa bakarrik geratzen da. Infinituki begira egon zaitekez, aluzinaturik, baina marrak eta koloreak ez dira bertsotzen. Interpretazino eta sentiera posible guztiak proba daikezuz, baina artelana materialki burutua dago. Musikan materialtasuna bera ari da interpretazino bakotxean bersortzen. Partitura ez da ikur bat besterik, faltarik be egiten ez dauena, buruz zabizenean. Paperean edo grabakuntzako uhinetan iradokitzen diren hotsak ez dagoz inon, fisika kosmikoko aztarnategietara jo ezik. Izandako hots guztien uhinak hor ei dabiz nonon, baina harrapaizak. Gure gozamen zuzenerako ez dira existitzen eta existitzen ez dena joten badozu, jaiotza total baten egile zara.

Musikaz beste edertasun asko dago munduan eta nire ahalmena hareitara iritsi izan balitz, segurrenik ez nintzen bertsolaritzan endredatuko. Jausi nintzen bertan, alde egin guran nenbilen, azkenean jarraitzea onartu neban. Gizajoa! Bekatx ditut askatasunaren aukera posibleen hautaketa etenbakoan sinesten dabenak, esperientziaz mintzo direla suposatzen baita. Desira inposibleen idealari askatasuna deitu badautsoe, ziraun erdibitua baino errukarriago dodaz. Ni behintzat saiatzen naz askatasunak anikila ez nagian, ez baita emoitza harrogarria aukera ezin lortuen eta koldarkeriagaitik ezin itxien artean gelditu jatzuna izatea, baldin izatea bera be derrigor izan beharrekoa besterik ez bada. Ondorio honetara iristen bazara, amaitu dira problema guztiak, (soluzinoa daukela suposatzen jakenak), derrigorrak berari men egiteaz besterik ez baitauka. Hau lasaitasuna! Bertsolaritzan jarraitzea derrigorra bada, (aurkitu dautsogu koldarkeriari formulazino positiboa), jarrai dagigun hankak zabalik eta paparra aurrera, horrela burua be altuago ibiliko da-ta.

Zer izango nintzatekeen, bertsolaritza itzi izan baneu? Sarri pentsatu dot, ez larregi arduratzen nauelako, pentsamenaren entretenigarri lez baino. Ez dot uste lanik falta izango nebanik, are gitxiago lan ruinosorik, urte batzuk geroago honeitatik ugari eta beha-



rrekotik urri gelditu nintzen arren. Iraganetik pozak eta minak bakarrik geratu jataz, inondik be ez aukera galduen, erratuen, ezinezkoen edo ezagutu bakoen penarik. Iragana orainera nakarren heinean bakarrik ardura jat. Eta bera luzatu ahala, geroa laburtzen delako. Nire kezka ez da joana, etorkizuna amaitzen ari jatala baino. Hori bai, denpora luzea pasatzen dot iraganean. Ezin dot zugatz bat besarkatu, lehengo neure zugatz lagunez oroitu barik, edo harri bat pirritan bota, neure oroimeneko harri eta malda guztien espresinoa nabaritu barik, edo olatu baten akaberari oinen kilikilia eskeini, itsasoaren lehen ikusteak eragin eustan mentasun inkondizionalaz hunkitu barik, eta segurrenik horrexegaitik botatzen dot harria edo igoten naz zugatzera edo ikutzen dautsot itsasoari, nire baitako iragan iraunkor guztia begerta daiten, baina hori ez da iragana, neu eta neure oraina baino. Horrexegaitik ari naz gozatzen, larogeiko txapelketa ondoko nire barne zirimola berreraikiz eta orduko bizipen bortitzek eta kurutzatuek, bortizki kurutzatuek, oraina zelan areagotzen daben sentituz. Izan neintekeena gehienik be desarreta dagoken eragozleen zerrenda besterik ez dela emonik, izan nazena bakarrik interesetan jat eta naturak beharbada, umezaro oropresente haretatik batez be, ezbeharrekiko minberegi egin baninduen, destinoak eskuzabal hartu nau, mundu honetako zortea zelan banandurik dagoen ikusita.

## Zergaitik

Sarritan ekin dautsot bertso faunaren erreakzino interrespezifiko ha zelan sortu zen edo zertatik eragin neban pentsaketan, fenomeno kontraesantsuak pentsamena atzemateko aproposak baitira. Denpora behar dozu anabasatik argitasuna bereizten eta, klabe nagusien bilduma osotutzat daukazunean, hasierara itzul zaitekez edo atzeraka abantzatu, (ondino ez dautsot pentsamenaren noranzkoari igarri), beste klabe batzuk agertzen jatzuz, gardenak

baina probisionalak eurok be, eta, aldian-aldian ondorio ezbardinakaz topo egindakoan, dana susmagarri bilakatzen da, batez be esplorazino guztien objektua norbera denean, azkenean berau be susmopean aurkitzen dozu-ta. Orduan pentsaketak nahitaez jarraitzen dau, ia bere kontura, interes pertsonalak edo beharbada urguluak jokatzen baitau, eta, aurkikuntza fidagarrirako bideak nahikoa inprobable ikusi arren, edo horrexegaitik hain zuzen, denpora intentsoki alperrik galtzeko karrilean sartzen zara. Hortik adikzinora itzal baten tartea baino ez dago, berau be atzetik ez badator.

Pentsatzen neban: «Bajjakiat zegaittik ixen dan. Goittik behera jeusi nok eta entzuliek behetik gorakoa bakarrik bereizten jjakijjek». Izan be, guztiz kasu atipikoa inkarnatu neban, aurkeztutako lehen intentuan Euskal Herriko txapeldun gelditu bainintzen. Gatx izango da barriro horrelakorik ikustea, nigan batu ziren zirkunstantziak (komentua, seminarioa, internatu luzeak, abadetza, espetxea...) nekez errepikatuko baitira. Bere ibilbidean esku hartzeko aukerarik izan ez denaren garaipena onartzea kosta egiten da. Hasierako errukian («Lasai! Hurrengoan hobeto egingo duk. Han izango gaituk animatzen»), jarraipeneko progresinoan, («Ikusten? Geroz hobeto zihoak. Honekin gizona atera behar diagu») eta emoitza garaian («Eskerrik asko! Zueri zor dizuet naizen apurra») entzuleak zelanbait bere partaidetza merituagarria ikusi behar dau. Bere talentu deskubritzailearen eta bere bultzada eskuzabalaren produktu ikusten ez bazaitu, estafaturik sentitzen da. Meteorito bat lez jausi nintzen, antza, zeinaren zartada baino molestoago den abisurik eta nonditasun jakinik barik etortea. «Non ikasi dik horrek bertsotan? Norekin? Nork ikusi dik?». Inor konturatu barik mahaipean sartu den basurdeari, sustotik bizirik urten badabe, eskopetak amorratuago kargatuko jakoz, oihanean agertzen denari baino, batez be norbera bila joan bada. Ikusle arruntentzat piztiarik maitagarrienak parke zainduetan gizalegez aurkezten direnak dira, sarrera ordainduta. Zure kolaborazinoak basatasunari forma bat emon dautso, ikuskizunaren



egile sentiarazo zaitu. Ni nahiko parke «zainduetatik» nentorren, baina, sarrera galazoak bide, mahaipeko intrusotzat hartu ninduen, «eta gainera begira nola eta nora begiratzen duen zerriak!». Ez dot uste basurdea hasarratuko denik, txarria aitatzeagaitik. Animaliokaz ikusleen sentimena mindu balitz, barrutian badagoz espezie finagoak, baina, behin sarrera familiarra ordaindu ezkero, danak ikustea merezi dauela suposatzen da, nahizta gero norbere gustokoak bakarrik gogoratu, sarritan alderantziz gertatzen da baina. Baten batek ikaratu bazaitu, kontuz sentsazinoa parke osora zabal ez dakizun. «Gaurko bertsolaritzak ez dik zerik. Ez dik graziarik. Ez dik hau, ez dik hori, ez dik besterik». Hizkera orokor hori gehienetan oso klabe esplizitua zen eta, oroitzapen pertsonalaz ganera, estimatzen neban nire izena parke orokorraren metaforan enkubritzen saiatzen zirelako. Halan be, ez neban sekula entzuleakazko iruzur asmorik izan eta neuk rekotxineoz hautatu bako eta asko kostatako zirkunstantziek jarri ninduen, ia berrogei urtegaz, txapelaren aurrez. Orduan kale eginda, entzuleen partaidetza lagunkorrez, hurrengoan karino gehiagogaz irabaziko nebala susmatu izan baneu, beharbada makurtuko nintzen, baina hori be ez zen segurua eta irabaztea pentsatu neban.

Bertsolaritzan guztiz periferiako sentitzen naz eta baztarreko eta erdiguneko sentikerak oso ezbardinak dira. Gipuzkoan («zoriontsuago» ipintera ninoan) gozatsuago bizi dabe bertsolaritzaren fenomenoa, euren mirari txikiaren ahogozoan. Periferian (nire periferian behintzat) ez gabiz hain sentipen baikorretan. Bertsolaritza nahikoa misterio sinpletzat eta apaltzat bizi dogu. Baztarretik gatxa da erdigunea kuestionatzea eta, nahizta ezer kuestionatzen ez ari, honek periferiaren diferentzia, desafiotzat hartzen dau. Periferia, barriz, bere diferentzia ezkutatzen ahaleginduko da, erdiguneagazko gitxiago-ustean, edo gitxietsi eingo dau, erdiguneagazko eder-guran.

Orain irrati-telebistetan... Zorioneko komunikabideak eta komunikazinoak, zeintzutaz jardutea hain hizpide bistosoa dogun!

Noan hiztegira.

*Komunikazino:* iz. 1. Barriketa. 2. Barriketa mota bat, barriketa hutsari gitxi deritxoenentzat. Denporapasa bat. Denporapasa aberasgarria, pasatze hutsari arruntegi deritxoenentzat. (Eta beste antzeko adiera mordo bat).

*Barriketa.* Ikus *komunikazino.*

Euskalgintza eta, orohar, herrigintza oro, taldez eta taldexkaz josita dago, milazak alkarte eta erakundetan. Bizitasun gutiori efikaziatik neurtzeak begiralea beharbada dezepzionatu egingo leuke. Esaterako, euskeraren irakasle bakotxeko, ez dakit urtean ikasle bateri euskeraz ganoraz irakasterik lortzen dogun, baina bejon, bitartean «giroa» sortu bada. Nago gure alkar-lan goraipatua ez ete den hainbeste helburuak lortzeko metodo bat, bizitzeko tankera bat baino. Moltzoan ibili, ari, eragin, lorkizunaren epeari erreparatu barik. Orduan barriketa ekintza bat izango da, hots, komunikazinoa. Eraikitzen dihardugu. Gero, jakina, buruak handitu egingo dira, beti opor preminan, ze, bardintsuak izan arren, barriketak desnekatu egiten dauen lekuan, komunikazinoak nekatu egiten baitau.

Orain irrati-telebistetan sarriago entzuten edo ikusten gaituelakoak nire sentipen periferikoari gitxi eragin dautso, gomuta adierazgarri bategaitik ez bada. Urteak dira Gasteizko produkzino-etxe batetik deitu eustena. Izenik ez dot agertuko, diskrezinoa eskergarriago izango dabelakoan. Gizona oso eragina eta eragitekoa zen eta telebistan bertsolaritzaren programa bat egitea proposatzen eban eta ea zer neritxon neu programaburu izateari.

—Iritzi? Beste galaxia batean harrapatu nauzu.

—Ez al litzateke gauza deigarria eta interesgarria bertsolaritza pantailagai bihurtzea?

—Ez nuke ezetzik esango, baina...

—ETBko jendea tentatu dut eta pozarren hartuko omenlukete horrelako zerbait.

—Ni programaburu naizela?



—Zergatik ez? Nork egin dezake zuk baino hobeto?

—Ez naiz pentsatzen ere hasi, baina nire izenarekin kostatzen zait sinestea ETBn programa bat sartzerik.

—Hori geure ardura da. Proiektu bat aurkeztea besterik ez dago eta badakit ondo egingo duzuna. Noiz elkartuko gara?

—Ostra!

—Ez al zaizu ideia gogoko?

—Gogoko, gogoko bai, baina nekatuta nago aurrerapide gabeko proiektuetan abiatzen.

—Ez zaitez horren ezkorra izan. Zein egun daukazu libre?

—Ba...

—Oso ondo! Hantxe iluntzeko zazpietan.

Lehen batzarra eta hurrengoak eginik, proiektuari zirriborro forma bat emon geuntson eta produkzino-etxeak ETBn aurkeztu eban. Egitekoak harremon handia eskatzen eban eta handik egun batzutara dinost:

—¡Oye! ¡En ETB les han encantado la idea!

—Programaren buru nor izango den garbi esan al diezu?

—Bai, bai, eta ez dute inolako eragozpenik jarri.

—Mirarien garaia ez da amaitu, antza.

—Proiektu zehatz bat aurkeztu behar dugu. Noiz elkar gintezke?

—Ba...

—Oso ondo! Hantxe iluntzeko zazpietan, gero afaritxo bat egiteko moduan, honek merezi du-ta

—Motibo txikiagoagatik geratu izan gara inoiz baraurik.

—Zer?

—Afaria behintzat ez digutela kenduko.

—Hori neure kontu. Getarian ezagutzen dut jatetxe on bat.

Gizona produkzino-etxeko emakume bategaz etorten zen, laguna edo andrea uste dot. Neu be inoz andreagaz joaten nin-

tzen eta afari entusiastikoa egin genduen. Ez dakit ETBko zein edo zeintzuk mailatan aurkeztu eban plana, baina telefonotik inpresino baikorrak zetozen, batzutan bere izakera asmotsuari egotzi ala ez zalantzatzen ninduenak. Baikortasuna luzatuz ziho-an, ostera, telefono deiak mehaztu egin ziren eta azkenean hasie-ratik bildur nintzena konfirmatu zen. Beste porrot batetik heurt egin beharrak bitarteko lan eta joanetorri alperreko guztiek baino ospelago itxi ninduen. Handik laster «Hitzetik hortzera» progra-ma estreinatu zen.

Beste gomuta (askoren artean) antzeko bat datort gogo-ra. Gomutak nondik ete datoz gogora, bertan ez badagoz? Eus-kaltegi batean nenbilen lanean, EGA emonez, eta behin hango zuzendariak, burua proiektuz betea eta gehienak burutzeko oldar berezia zeukanak, dinost:

—Hi! Hiretzat plan itzel bat yekoat. Aldundiko behargineei euskerazko klaseak emotea ixingo litikok, eurek ixentauko leu-kien lokal batean. Beharra ez dok handie ixingo, baie ordaine lodie.

—Hori komonidu yakuk, ba! Txarri yakana eta lodie. Nire ixenagaz urtengo deuela uste dok?

—Hori euskaltegien ardurea'ok. Egie esateko, guk bitar-tekotzea baino etxuk ingo, baie behin abiau ezkero, bolea berez yoang'ok.

—Zeozer eiten b'ok, mun emonda hartuko yuk.

—Inde yaok. Konforme orduen?

—Da, zegaitik eta hagaitik, denpora batera behar hori amai-tuko balitzok?

—Orduen beste hobeao bat topeko yuk. Txarrenean be, euskaltegie beti yaok hemen.

Plan ha be, nahikoa aurera joanda gero, bidean galdu zen eta ez da gatxa zergaitik igartzen. Aukera politiko jakin bateri oso loturik agiri ginenon askara nekez jausiko zen pagotxarik. Tarte-an beti gertatzen zen kasualitateren bat, kasualitatera garbi irit-



tsiko ez zena, baina ondorioa bardin ekarriko ebana. Zerga hori, beste askok lez, ondo asumitua neukan, baina batzutan gauzak hain sinesgarri azaltzen jatazen, ezen ilusinoari aurrera joaten izten neutson eta azkenean neure inuzentekeriaz ernegetako beste motibo bat pilora. Ezer lortu ez eta norbere burua apur bat gehia-go gorrotatu behar.

Bertsolaritzara eta periferi kontura itzulita, giputza izan banintz, oso beste era batera bizi izango neban historia guztiau. Ez dakit era emonkorragoa, baina ziur askoz erosoago eta lorio-sago izango zela, bai erdigunean, baita Bizkaian bertan be, non euskaldun askorentzat etxekoa gitxiestea erdigunearen ederra irabazteko modua den. Bizkaitar bateri kantaiozu «inor ez lako-ak zarie» eta jasan egingo dau. «Etxeko kontuek! Horrek pen-tsetan jjok gu ikopien bixi garíela». Giputz batek «jatorrak zera-te» kanta begio eta izerditu egingo da emozinoz. «Etxeko» esa-tean, ez dot neure etxe nagusitzat Euskal Herri osoa ukatzen, dana be handia ez dena, baina bertsolaritzan ahozko hizkuntzan gabizen ezkero, Mendebaldeko euskaldunok oso etxe ezbardina osotzen dogu, etxe abandonatua sarritan.

Ez da kantatzea bakarrik, inguruko harremon guztia baino. Oso diferentea da bertso inguruko gizarte osoa, orain komunika-zinoa esatea hain gustoko dena, batuan edo beste euskalki bate-an gertatzea ala norbere euskalkian. Batuan edo euskalki arro-tzean eguna pasatzeak oso neke ezbardina eragiten daust neure euskalki barruko nekearen aldean. Neke fisikoa bardintsua izan daiteke, baina mentalki ez dauka antzik. Euskalkitik kanpora abiatzean, ezin dot ekidin «etxetik kanpora» jokatzera noan sen-tsazinoa, baina hortxe dago alukeria, Bizkaiko entzuleen jarrera sarritan alderantzizkoa baita. Jagiago, baikorrago sentitzen dira giputzen aurrean. Etxekoen aurrean, barriz, makurrago, lotsa-tuago, batez be euren euskalkian kantatzen bajake, horretarako aukerarik aurkitzen daben bakanetan. Bertsolaritzaren kanonak Gipuzkoatik etorritzat daukezen ezkero, hangoak gura dabez

nagusi eta, hemengoak izatekotan, hango modu eta estiloetan eta ahal dela, hango hizkeran. Beste periferiak ez dakit zelakoak direnik baina Bizkaikoa baino kokoloagorik nekez izango da euskera kontuan. Zorionez egoera apur bat aldatzen hasi dela dirudi.

—Hi nongoa haz, atrebentzi handitxoa ezpadok?
—Gipuzkoakoa. Herrie be esan ein be'otsut?
—Giputzek abilek zarie. Geurea be polito eit'ok hik.
—Bizkaitarra naz-ta!
—Ah! Bañengoan, ba,hemengoa lartxo eite'indule!
—Hemengoari eztotsezu asko erizten, ezta?
—Hau ona ixin balitzok, giputzek be ikisiko yerean apur bat.

Honelako autu behin eta barrirokoek, unean bertan jolasgarri izan arren, luzera behelainoa sartzen dabe gogoan, zenbat eta jasotzeko itxura gitxiago euki, hainbat eta etsiago sentiazoten zaituena. Periferia baten beste periferiagazko erlazinorik kontzienteenak nekez harainditukо dau erostaren batasuna, gehienean bere buruaren identifikazinorik be ezin dau osatu-ta. Futbolari edo bankari izan banintz, ez neukeen erlazino honeitara jo beharrik, baina bertsolaritzak nahikoa kokapen makalean harrapatu gaitu.

## Ni Trebiñotar

(De lamentatione Amuritzae Profetae).

1)

*Gipuzkoako aldizkari bat deitzen dena BERTSOLARI*
*ale aparta eman diona oraingoan Bizkaiari.*
*Nitaz zer zion begiratzean, ez naiz inondik ageri*
*irakurleek ere faltarik ez bide dute nabari*
*Judua ez naiz, Agota ez naiz, Trebiñotarra al naiz ni?*



2)

*Noizbait ni ere deskuidoz-edo hasi nintzen bertsogintzan*
*ikasia ta ez-berezkoa nintzela erabaki zan.*
*Erudituek hori zioten berezko sasi-jakintzan*
*bertsolaria eskolarako kontra-jaioa bailitzan*
*mintzen ninduten baina ez mozten Trebiñotarra bainintzan.*

3)

*Lehen txapela irabaztean post-xalbadorismoaren*
*dekadentzia hasi nuela zenbait bekaiztik zioen.*
*Hain minki mintzo ziren gaizoak, ezen ia zirudien*
*Pandora-kutxa pertsonalen bat desgiltzatu ote nien.*
*Eurak barruan harrapaturik, lerde berdea zerien.*

4)

*Beste batzuek argiagoak, baita zitalago ere*
*maixatu zuten izan nintzela zenbaitzu gairen jakile.*
*Pentsatzen nuen: «erremin hori zerk eragin ote die?»*
*Lepoa jarri behar al nuen txapel huts bat zela bide?*
*Arroztu nintzen Trebiñora ta hantxe aurkitzen naiz libre.*

5)

*Hurrengo deman finalerdia zela Idiazabalen*
*frontoian zehar kartzela-gaia kantatzera banentorren.*
*Txalo izpi bat ez nuen jaso, guztiak hilda baileuden*
*gero besteei joak entzunez barneki pentsatu nuen:*
*«Eutsi, Trebiño! Lagun bakarra heure buruak duk hemen».*

6)

*Gero bigarren finalerdia jokatuko zen Durangon*
*han ere zenbait feministakin ez nuen izan hainbat on.*
*Motibo zerbait sortu banien, ez dut ukatuko inon*
*baina halako gibelekorik ez didate sarri emon*
*Bokassarekin neu parekatu, nahiz urtetan preso egon.*

7)

*Anonimoak EGINera ta anonimoak etxera*
*azken asteko burrunban ez zen kalaka gozoa bera.*
*Ez dakit nola apaldu ziren izenak ezkutatzera*
*berehalaxe jakin bainuen, galdetu gabe gainera*
*halako lagun finen animuz heldu nintzen finalera.*

8)

*Halare, jantzi nuen txapela bazen minen aski sari*
*«argitu behar ditiat —nion— lau egi eta bost begi».*
*Hara non gero ez aldizkari, irrati ez egunkari*
*inork ez zidan hitz bat eskatu, hau ere nahiko marka, hi!*
*Trebiñotarren legena edo biraoa ote da hori?*

9)

*Ondorengoan Euskaltzaindia pentsatu zen lagatzea*
*bertsolariek hautatu zuten batzorde eratzailea.*
*Kartzela-gaitzat erabaki zen jartzea esposa parea*
*hurren bileran batek gordinki dantzatu zuen sablea:*
*«Hori da, jaunak, Amuritzari txapela erregalatzea».*



10)

*Batek hots egin bestek men egin, ez zen beharko ezetzik*
*«Bandoa» joaz ez nuen egin tokatzen ez zen ametsik.*
*Banakaren bat penatuko zen, beste guztiak zer pozik*
*ez soilik etsai politikoak, hizki berekoak baizik*
*«Eskerrak baden Trebiño ere! Ez hago hain nora ezik».*

11)

*«Gizona ez da bakarrik ongi» zioen Jainko poetak*
*Anje Duhalde tentatu nuen eta ontzat hartu berak.*
*«Txoriak eta txoriburuak» uxaturik edozenbat*
*noizbait «Hitzetik Hortzera»n ere egin ziguten tarte bat*
*ez zen aukera muzingarria Trebiñotar soil batentzat.*

12)

*Gero Zarauztar anonimo bat EGUNKARIAn kexu zen*
*programa hura desjatortzera nola eraman ginuzen.*
*Lasai, txikito! Uste al huen betiko ote gentozen?*
*Jaso diagu hi flautajole hautenen mezua, ezen:*
*«Ez eman horri kantxarik hemen! Trebiño bego Burgosen».*

13)

*Bertsolaritza sateliteen menpeko planetatxoa*
*ez naiz berezko ez perretxiko, ez lehengoa ez gaurkoa.*
*Ez naiz ardia ta gutxiago Ardi Batasunakoa*
*neure orbitan hegatuko naiz, neure galaxian noa*
*Trebiñotarren aireak marka estelarra baitaroa.*

14)

*Geroztik gero aldizkari bat, BERTSOLARI du izena*
*ale berezi bat Bizkaiari eskaintzeko egin zena.*
*Bertan ni falta izanagatik, osoa eta gizena*
*bertsolaritza moderno hori asko jantzi duk, gizona!*
*Kultoek ere gaur bazekitek Trebiñotarra naizena.*

Bertso sorta honen motibo zuzena lehenenengo bertsoan agertzen dena izan zen. BERTSOLARI aldizkariak Bizkaiko bertsolaritzaren ale berezi bat etara eban. («BERTSOLARI. Bizkaia. Ale berezia. 1992. urteko Abendua, 8. zenbakia). Zuzendaritzak lanen egileak bizkaitarren artean bilatu abazen eta honeitako batek niri proposatu eustan Lopategi eta Azpillagari buruzko ez dakit lan osoa ala zati bat burutzea. Nik, orain gogoan ez daukadan arrazoiren bategaitik, ezetz erantzun neban, segurrenik ale bereko erreportaia batean egile eta bestean protagonista agertzeari ez neutsolako eritxiko. Behintzat ale bereziaren asmoaz jakitun jarri nintzen. Egunak joan ahala, pentsetan neban: «Nor ete jjabik niri buruzko artikulugiñen?». Pentsetan neban zena zelako egileak nonoz nigana jo beharko ebala, itaunen bat, eritxiren bat, daturen bat jasotera, baina inor ez zen agiri eta apur bat kezkaturik nenbilen, ea zer erreportaia moduk urtengo eban, pertsonaiagaz ezetako kontatu barik. Azkenean delako alea iritsi zen eskura eta hango argazki, titular handi eta orri sorta luzeen artean, neure izenaren bila errezeloz niharduen, «zelako astokerijjek ipiñi et'ostiezak hemen?» pentsatuz. Lehenengo pasadan artega samar edo, ez neban ezer aurkitu eta horrek aztoratuago jarri ninduen. Bigarrenean orriak banan-banan pasatzen hasi nintzen eta Enbeitatarrak, Lopategi eta Azpillaga, gazteak, eskolak, bertsolaritzari iztea erabagi ebenak... orriak amaitzera zihoazen, bihotza lokietan kolpatzen zen eta, eztanda sorpresibo baten bildurrean, azkenean okerrena eta gitxien ustekoa aurkitu neban: hutsa. Nitaz ez zetorren ezer.



Lehenengo erreakzinoa depresio totala izan zen, zelan hainbeste pentsakizun eta aieru gratuito egin neban, azkenean ezerezean plof egiteko. Amesgatx anikilatzaile horreitan lez, non, zure etorrerari buruzko espektazino itzela sinestu eta haretaz hanpatu ondoren, azkenean trenetik jatsi eta inork ez zaituen ezagutzen, inor ez dago zure zain, bakotxa bere maletakaz eta bere lagun edo senideakaz aldendu da eta geltokian, okasinorako entusiasmoz prestaturik ekarri dozun zeure buruaren erakusketarako artxiboa eskutik dingilizka, burdinazko zutabe mehatzen, batzuk ostruka zangoak lez okertuen artean, bakar-bakarrik zagoz. Konturatu zareneko, trena joana da eta zuloan errailen lerroak eta euron trabesak bakarrik ikusten dozuz, norabide desagertuen ganean. Bigarren erreakzinoan, hasarratzen eta amorratzen hasten naz. Andreari dinotsot:

—Beittu zer dakarren honek nitaz.

—Hemen ez dator ezer! –harritzen da ha be, orriak behin eta barriro pasatu ondoren.

—Horixe diñot, ba! Ezebez! Horixe gara gu. Ezebez!

Geroago, ez berariaz eta erreklamazino gisan, jarrera honek gehiago apalduko baininduen, bide batez eta ahalik arduragabeen baino, aldizkariko arduradunari galdetuko neutson ea ni nortzat edo nongotzat edo zertzat nindeuken. Azalpenetatik, despiste bat izan zela etara neban, esan baieustan:

—Beharbada hi Euskal Herri mailan kontsideratuko hinduten.

—Baina Euskal Herrian, leku jakin batekoa izango nauk, eztuk? Zer irudituko litzaiake Gipuzkoako ale berezi batean Egaña-edo faltatzea?

—Ez zakiat. Inor ez duk konturatu.

Deskuidoak ulertzeko gauza banaz, baina nire indiferentzia ez da despistegai soil bat izana asumitzeraino heltzen, batez

be nire faltari inork ez eutsola garrantzirik emon ikusi nebanean. Badakit honeik oso bizipen pertsonalak direla eta ez dagoela pankartak etaraten hasteko motiborik, baina gitxienez, nonogaz komentatzen dozunean, kortesiaz bada be, zure kexagaz bat datozen planta batzuk itxaroten dozuz. Ez nintzen askorekin konfidentziatu, orbel baten pasaerari baino garrantzi handiagorik ez eutsoela emoten eta autua freskura osoz aldatzen ebela ikusiko baineban, eta neure dezepzinoa isilean jatea pentsatu neban.

Honetan eta beste hamaika abagunetan obserbatu izan dot —eta behar diren ondorioak etara— solasak gai arinari edo, garrantzitsua bada, inpertsonalari ekin behar dautsola, egotismo kolektiboaren jasaile izan nahi ez badozu. Nonor bere umearen mirakuluak kontatzen ari bada, (eta norbere umearen kontuak, arinenak eta arruntenak be, mirakulu dira), nekez itziko dautsoe amaitzen, besteak be tarterik txikienaren zain baitagoz, «ba, gureak be...» hasteko. Edo zeure herriko kontu ustez interesgarri bat amaitzear zagozenerako, hirulau aho somatzen dozuz «ba, gure herrian hori baino...» abiatzeko prest, solasaren bizitasuna edo alkarrizketa bedeinkatu horren klabea gehienean nork nori aurrea hartzearen edo, danak lehenengoak izatea ezinezkoa denez, nork nori hitza kentzearen gorabeheran baitago. «Ederra gertatu yatak» hasten zara kontatzen, argumentuari analogiaren bat aurkitu arte entzungo dautsue, hortik aurrera ibil zeintekez arin eta ozen, laster sartu baita nonor: «Ba, niri handiagoa yazo yataan!». Zu atzokoaz edo egunean bertakoaz ari zinen eta harek orain hogei urteko pasadizoa etara dau, baina zer egingo dautsozu, ba, haxe baitu berea, ez zuk dakarzun aktualitatea, eta zoriontsua zu, kondaira amaitu ahal izan badozu. Orduan, otzan samarra bazara, zeozergaitik hain barneki ikutu zaituen hataz, galderak edo zenbait xehetasuni buruzko garapen eskeak itxaron zeinkez, baina laster ikusiko dozu beste istorio interesgarriago bat abian dela eta solaskideen arteko inor ez dela gelditu zure sentimenari adi, zeinak bere burua, une oso kontzientea gertatu bajako, bakartate solaskidez



biderkatua nabarituko dauen, ez luzerako, zeu be, interes pertsonalen ganeko konbentzino komunikatiboen jakile, laster jarriko baitzara bestearen entzule, baten batek «nora begira hago» edo «zer barri iretargian» galde ez dagitsun. Gero barriro hasiko zara beste zerbaiten kontari edo «lehen ninoena amaitzeko...», eta ezin zara eskarmentatu, segurrenik gauzak ez baitira inork entzuteko esaten, dagozen lekutik urten dagien baino, edo mogitu behintzat. Berbak mihin puntatik askatu ziren eta, panorama ikusita, euren gordegura itzuli dira, baina bidaiak merezi eban, lengoaiaren miraria zabaldu baita. Astiro-astiro, lagunartean lasai ibilteko portaera oso praktiko batera heldu zara: «Autu atsegina gura badozu, ekidin zeure sentipen pertsonalegien erreferentziak».

Halan be, berba egiten badozu, beti pairatuko dozu behar baizen aintzat hartua ez izatearen minsorra, diren gai eta gertaerarik inpertsonalenek be, zeuk kontatuak diren heinean, zeure antza hartzen baitabe. Solasean parte hartzeko modurik plazidoena isiltasuna da. Horregaitik, zeure sentipenei buruz ekinkor samarra bazara, laster hartuko dozu kalaka fama eta orduan, luzatzeko asmorik ez daukazunean be, buruak apur bat albora guran hautemango dozuz, nondik disimuluan aldegingo lez, baina normalean kalakariak aurreko posizinoen usnarik ez daukan ezkero, ahal dauenak zugaz berbatu aurretik saihestuko zaitu eta zure ahalbide bakarra baina segurra da beti dagozela toki desfaborablean aurkitzeko zorte txarra dauken inuzenteak. Denok gara kalakari, geure bulkoa kontroletako argitasunik ez daukagun unean, edo hitzari korritzen izteko bildurrak mugatzen ez gaituenean. Orduan nahikoa da solaskideak kunplituzko galdera bat egin dagiskun, kalaka bariatzeko asmo soilez segurrenik, galdegaiaren xehetasun guztiak, aurre-ondorio guztiakaz, kontatzeko justifikaturik, beharturik areago, senti gaitezen, baita delako kasuaren analogiak be, egiazkoak zein alegiazkoak, ze errealitatearen ikuspegi murritza eukitzeak ez dau esan gura hizjarioa amaituko denik, beti baitago «nik uste dot», «nik esango neuke» erre-

gistroetara pasatzeko zubi erreza, eta nahizta bere kabuz irudipen edo esankizun gitxi euki, bere eritxi apurra moldatzeko, bizitzak entzunazo dautsozenak konta daikez, «gure aititek esaten yoan», «gure albaitari herrenak», «atzo bertan andreak esan yeustan»..., eta orduan barriro kasuagaz zerikusi argia daukan errealitatera itzuli jatzu, kasu guztiak baitira errealitatearen ganean gertatuak.

Ez! Berben ugaritasuna ez dago talentuaren edo jakintzaren gorabeheran, entzulearen pazientzian baino. Batzuri baleiteke entzule faltak benetan sufriarazotea, baina gehienean berbalduna ez da berba eginez husten, ekinago eta berba gehiago geratzen baijako, eta bariazinoa ez da problema, istorio beraren errepikak, sarritan ia testualak, nahi besteko luzapidea emoten baitau. Normalean errepikatzaileari gogaikarri fardela eransten jako, baina bariazinoa bera be zer da, ba, grina beraren aldaera besterik, entzulearentzat jasangarriago izan arren? Honeik guztiok eta gehiago hauteman ahal izan dot begi-belarriak baliatu ahal izan dodazen jentarte danerikoetan, bai besteakan, bai neure buruagan. Okerrena da, besteena bilakaeraren simultaneoa den bitartean, norberea gehienean ondorengo oharkuntza izaten dela eta orduan ez nau hainbeste ernegatzen gogaikarri fama irabazi izanaren pentsamentuak, neure erreferentzia hain pertsonalak inguruko indiferentziara jaurti izanak baino.

Bizkaiko bertsolaritzaren alean nire izenik ez aurkitzearen zaputza inori aipatzetik arretaz begiratuko banintzen be, —eta barriro dinot ulertzen dodala deskoidua, gero, agian huts haren ordainez, ale monografiko bategaz zuzendu ebena, (BERTSOLARI. «Amuriza, bakarra». Ale berezia. 1994. urteko Abendua, 16. Zenbakia), beraz, ez daukat kexatzeko motiborik eta ari be ez naz kexatzen ari, ulertzeaz azpirago dagoen une bateko sentipen bat deklaratzen baino —, ha abiagune zela, bertsolaritzak nire gogoan itzitako zenbait gomuta mingarri bertsotan jarteari emon neutson. BERTSOLARI aldizkariko kasua gertatu ez balitz, honelako bertso sortarik ez neban beharbada inoz jarriko.



«Ni Trebiñotar» izenburua lehen bertsoak ondo esplikatzen dau. Honi azpi-izenburu bat jarri neutson: «De lamentationae Amuritzae profetae». Hau abadegaitan hainbeste aldiz eta zirrara handiz kantatutako «De lamentationae Jeremiae profetae» izenekoaren aipu literala da. Jeremias profetaren erosta luze eta hunkigarriak aste santuan kantatzen ziren eta bai testua, bai musika eta, oro har, erostak bideratzeko modu ha, atxikita geratu jatazen. Neuk be neure erostak kantatzea pentsatu neban eta musika be Jeremiasen erosta doinutik garatua da, hamarreko handi honek gregoriano aire osoa daroala.

# 8. Bigarren txapela

## 1982KO TXAPELKETA AURREA

Lehen bertsoetan larogeiko txapelketari buruzko kontuak aitatzen dira, arestian azalduta itzi dodazenak. Bosgarrenetik bideratzigarrenera larogeta biko txapelketako kontu batzuk datoz, ez danak, noski, baina bai kexu gisan gogoangarrienak. Larogeta biko txapelketak espektazino handia sortu eban, aurrekoan aurkeztu bakoak be bertan baitziren, batez be finalera heldu ziren Lopategi, Lazkano, Lizaso eta Peñagarikano. Beste laurak larogeiko finalekoak ginen: Azpillaga, Garmendia, Enbeita eta ni neu. Motibo bategaitik edo besteagaitik, txapelketa guztiek sortzen dabe egundoko ikusmina. Larogeta bikoa niretzat barriro erronka gogorra zen, ondo bainenkien baztarretan esaten ari zirela: «Aurten ikusiko diagu zer egiten duen horrek». Txapelketa ha oso oinarritik eta aukera guztiz edegian hasi zen, nahizta bertsolariak «A» eta «B» mailetan banantzea ez zen erabagi maitagarria izan. Aurreko txapelketan be Euskaltzaindia prest egon zen, eredu hau aplikatzeko, hots, parte hartze edegia emoteko, baina bertsolarien artean txapelketaren alde eta aurka sortu ziren tirabiren ondorioz, azkenean batzorde antolatzaileak hautaturiko hamaseiren artean jokatzea erabagi eben.

Oraingoan hirurogeta lau bertsolarik emon eban izena. Niri zegodanez, aurreko txapeldun gisan, antolakuntzak finalean zuzen sartzeko eskeini eustan aukerari uko egin neutson. Ez naz gogoratzen bigarren geratu zen Enbeitak be eskubide bera izango eban, baina txapelduna sartu ezik, txapeldunordea sartzea ez zegoen planteatzerik. Finalera zuzen sartzea bidebage ikusten neban

eta ikusiko dot beti eta ez naz gogaituko esaten hori abusotzat joten dodala, nahizta larogeta seian neuk be finalera zuzen sartu behar izan neban, bertsolarien eskura etorri zen antolakuntzak halantxe erabagi ebalako. Inor finalean sartzea abusotzat joten badot, finalistak kanporaketaren lehen faseraino jasteari be ridikulua deritxot. Hor badago erdibide bat, zentzunak begien bistara emoten dauena.

Larogeta bian Enbeita eta biok finalerdietan hastea erabagi zen azkenean. Nik neure aldetik, justizi kontuak alde batera itzita, nahiago dot gitxienez kanporaketa batetik finalera iritsi, egun bakarrean eta partida bakarrera dana jokatu barik. «Eta finalerdietan sailkapenetik kanpora gelditzen bahaz?». Betiko atxakiak. Txapeldungai batek finalerdiak gainditzeko zailtasunik ez leuke izan behar. Egun oker batek baztarrean itzi zaituela? Eta zer? Baztarrean ez gelditzeko bildurra al da gailurra irabazteko meritua? Egia da hirurogeitik hirurogeta zazpira aplikatu zen eredua —garaiko pilota txapelketatik kopiatua— bidebageagoa zela. Hareitan, Basarri eta Uztapideri gertatu jakenez, txapelduna finalean be zain egoten zen, beragaz saio bakarrera eta buruz-buru txapela jokatzeko kandidatua nor izango. Kanporaketa guztien azken zentzuna txapeldunari kontrario bat izentatzea zen. Halan be, eredu harek baeban geroko txapelketek finalari errukarriro moztuko eutsoen progresino bat. Goizean zortzitik lau pasatzen ziren arrastira, honeitatik bat pasatuko zen aurrera eta honek eta aurreko txapeldunak beste saio luze bat egingo eben, txapeldun barria erabagiteko. Halan finalak hiru plano guztiz ezbardin eta goranzko zeukazen, ekitaldiari abiadura eta emozino gehikorra ezarriz.

Larogeta bian bertsolarien aldetik ahalegin handiak egin ziren larogeian ezarri zen progresino hondakin bakarra (lehen-bigarrenen arteko saio bategaz amaitzea) eliminatzeko. Bertsolari gehienek, batez be euren burua txapeldungai ikusten ebenek, ez eben finaleko fase ezbardinen konturik entzun be egin gura.



Lehenenengo bien arteko azken saioari behintzat eustea gitxienekoa zela gogor defendatu izan ez baneu (eta txapeldun lez nire hitzak indar bat zeukan), larogeta biko desenpatea pikutara joango zen. Eusteko arrazoiak, baita progresinoa gehiago zabaltzekoak be, jokoan zuzenki sartuta ez dagozenentzat, begien bistakoak dira ikuskizun, kalitate eta entzuleen balorapen aldetik. Azkenean, tirabira luzeen ondoren, larogeta bian erabagi zen, lehen-bigarrenak honenbeste punturen barruan geratzen baziren, (dozena baten bueltan uste dot), desenpateko saio bat jokatuko ebela, zeinaren puntuaketa aurretik zekarden kopuruari gehituko jakon. Larogeian zegoen aldea zegoela egitekotzat onartu zena, larogeta bian desenpate hertsira mugatu zen eta, halantxe gertatu zenez, desenpatea jokatu genduen Lopategik eta biok, baina batak edo besteak puntu gehiagoren aldea etara izan baleu, azken gailur ha ezerezean geldituko zen. Zorionez, jokatu beharra gertatu zen.

Lehen-bigarrenak agertu eta beste guztien sailkapena ezkutatzea ez zen aldatu, nahizta hori be zentzubakoa zela defendatzen ahalegindu nintzen. Beharbada, orohar, azkenak ezkutatzea lasai onartuko neuke, jenteak lasaiago kantaturik, kalitateak irabaz dagien. Bertsolarien txapelketak, ahal den neurrian, garaipenak nabarmentzeko eta porrotak disimulatzeko izan behar dau. Ikuskizunaren, emozinoaren eta kalitatearen bila goaz eta horreik normalean lehen postuetan garantizatzen dira. Lan kaxkarragoak sailkatzeak taldearen batez-bestekoa jatsi egin daike, edo, alderantziz esanda, azken postuak ez direla hain bistan geldituko jakiteak alperreko urduritasun bat ken daike eta, ondorioz, kalitate handiagoa bideratu. Hori guztia txapelketaren osotasunean egiterik ez dago, noski, finalean sartzen ez direnek nahitaez bistan eliminaturik geratu behar baitabe, baina txapelketaren fase guztietan aplika daiteke erizpide bardintsua, aurrera doazenak eta postu onak nabarmenduz eta atzekoak ex aequo karinoso batean babestuz.

Halan be, larogeikoa eta larogeta bikoa gehiegizko pre-

kauzinoa izan zen. Hirugarrenak kirol eta jardun gehienetan ohore handiko podiuma zapaltzen dau. Laugarrena lotsagarria al da? Hortik aurrera bardinean bota daitekez, bosgarrena be txarra ez den arren, baina postuak atzeregi erakusten badira, azkenak bistaregi geratuko dira eta orduan bilatzera goazen efektu biguntzailea hausi egiten da. Zortzitik lehen laurak izentatzeak aurreko postuak ondo adierazoten eta atzekoak nahikoa ezkutatzen dituela uste dot. Finalean lez, arteko maila guztietan be proportzino bera aplika daiteke, fase bakotxean erdiak (sei badira, hiru) izentatuz. Eta, jakina, puntuaketaren arabera aurrera pasatzea dagokenak. Gerta daiteke talde bateko bosgarrenak beste bateko bigarrenak baino puntu gehiago etaratea. Oraingo sisteman egiten denez, beharrezko al da eskilara osoa bistaratzea? Finaleko sailkapenari gagokozela, badira honelako arrazoiketak:

—Finalean sartzea beste barik aski garaipen dela, zer ardura dautso gero zazpigarren ala zortzigarren sailkatzeak, batzutan eurok geratzen baitira gustoren?

Halan izan daiteke finalean lehenengoz edo pronostikotik at sartu direnentzat, baina horrek ez dau esan nahi beste ereduan bardin gustora edo gustorago geratuko ez litzatekezenik. Kontsidero honeik guztiok bertsolarien erreparoetatik datoz, ez beste inondik. Partaideek tentsino puntu bat gitxiago jasateko eta, ondorioz, kalitate hobeko saioak etarateko balio badau, zergaitik ez hor be erdibide bat ezarri? Txapelketa zelanbaiteko lehia izatea ekiditerik ez dagoen ezkero, (ergelkeria litzateke hori pretenditzea), bigundu daiguzen, ahal den gehien, jokoaren alderdi bildurgarriak. Bertsolaritza ez da lehia inexorable bat, non, batzuk igoteko, besteek jatsi behar daben. Biguntze hori ez dago erabat lortzerik, kanporaketa sistema bat nahitaezkoa baita, eta orduan, batzuk aurrera jarraitzeko, beste batzuk nahitaez atzean geratu beharra dauke, baina fase bakotxean atzera gelditzeko moduak zorrotzak edo estaliagoak izan daitekez. Ez daukat eze-



lako morborik —edo ez neuke euki behar —, atzeko postuen induskketan gozatzeko. Entzulea be horretara gogoz errendituko litzateke, partaideen alperreko sufrimentu bat kentzeak ekitaldi lasaiagoak eta distiratsuagoak ekarriko dituela pentsaturik. Ziur nago horrelako formula orekatu batek eragin ongarria izango leukeela. Eta pedagogikoki be, gizarte zabalari begira, lehia sanoago eta gizakorrago baten eredua eskeiniko leuke.

Larogeta biko txapelketara zer aldarte eroan neban ez daukat larogeikoa bezain zehatz gogoan. Hemen xaloago, edegiago, ilusino baten bila lez joan nintzen. Larogeta bian askoz jarrera nahasiagoan nengoen. Helburu bat lortzeko garrari lortua galtzeko bildurra gainditzen jakon. Ez zela ezeren galtzea buruak ondo ulertu arren, sentimenaren beste terminaletara seinale ahulak iristen ziren, laurogeiko txapelketaren ondorengo erreakzino kontrajarriak bide zirela, neure burua estigmaturik ikusten baineban. Orduko lana gainditzea zail ikusten neban eta bardintzeak zetako balio zeikeen, lehengo muzin berak berresteko baino? Larogeta biko txapelketa aurrea askoz mogituagoa izan zen, ia bertsolari andana guztia abian jarri baitzen. Aurrekoan txapelketa bai ala ez eztabaida luzeak izan ziren, baina oraingoan txapelketari berari buruzkoak nagusitu ziren. Danok genbizen atzera-aurrera eta horrek nigan urduritasun handiagoa eragin ebala uste dot. Uste dot, dinot, gomuta lanbroagoa, ospelagoa baitaukat. Larogeian, hondartza garden batean bilozik, lehenengo olatuaren bila abiatzeko inozentzian aurkitzen nintzen. Larogeta bia hatxetako ur arriskutsuetara saltatzea izan zen. Ur gardena, baina zoru bildurgarria. Larogeikoaren ondoren, bertsolaritza iztekotan egon nintzen. Orain pentsetan neban: «Orduen koldarra ixen ezpanitz, oin enajjekoan kinka honetan ibilli biherrik». Halan be, joanari izteko eta etortzekoari begiratzeko, baneban nahikoa kemen, horretan zentratu nintzen eta uste dot lortu nebala.

Kemena. Hortxe dagoela uste dot gorabehera nagusia, nigan behintzat. Kementsu aurkitzen nintzen eta, orohar, laro-

geta bian be bildur baino ilusino handiagoa neukala uste dot. Dana dala, txapelketa aurre hartaz nahikoa oroitzapen nebolusoa daukat, larogeiko oskarbi sentsazinoaren aldean. Hemengoak milaka xehetasun gogoratzen dodaz, nire barne egoera gardentasun osoz bereizten eta sentitzen dot oraintxe be, segurrenik lehenengoa izatearen zirkunstantzia markatzaileagoagaitik. Hurrengoan, denporaren eta tokien zehaztasun bako eztabaida anitzez ganera, Idiazabalgo finalerdira arte ez daukat gomuta garbiegirik.

## IDIAZABAL

Larogeta biko txapelketaren gomuta niretzat Idiazabalgo finalerdian hasten da, beharbada hemengo gertaera batek biziki jo ninduelako. Ha ez dot uste alzheimerrak be ezabatuko daustanik. Goizeko saioa bazihoan aurrera eta kartzelako gaia heldu zen. Zeberiori, lehenengoa izaki, geratzea tokatu jakon eta beste guztiok ostera. Pilotalekuko jaztegian prestatua zeuken egoitza. Niri bigarren tokatu jatan eta, beraz, kartzelatik urteteko lehenengoa nintzen. Oso gogoan daukat, tokira iritsita, zelan besteen barriketari jarraitzeko gogorik ez neukan. Zelebrea da horrelako egoeretan, urgulu aldrebes ulertuan, zelako jaiton plantak egiten doguzen, zirkunstantzien ganeko indiferentzia guzurrezko bat agertu guran, kontzentrazino ahalegina dependentzia desondragarria bailitzan. Nik neure baitan zentratu nahi neban, orduan eta antzeko okasino guztietan, eta ez jat gustatzen inork galdera suntsunez edo iruzkin topikoz molesta nagien, areago aurrenen urteteko nintzela. Urrungo txalo hotsetik igarri zen Zeberiok amaitu ebala. Kartzelako atea edegi zen eta, eroaleak zeinu eginik, baninoan jaztegietan zehar.

Pilotalekuko atea edegi eta jentarteko pasabidea zapaldu nebanaz batera, marmar ozen eta trinko ha zart eten zen. Bakartatea baino isiltasun narrutuagoan sartu nintzen. Sen erraturen



batek itxaronazo eustan txalorik ez neban entzuten, ezta imintziorik be. Zeozer arraroa, oharkabea sentitzen neban, neure pentsamentuan zentraturik ninoala. Neure oin hotsa bakarrik entzuten neban eta belarrietako dunduri kolpekaria. Pilotalekuaren erdian oholtzarantz hartu nebanean, urkabera bideko abandonua begitandu jatan. Burua neure bakar gairako pentsamentuetan (doinu eta abar) zentratzen saiatu bitartean, euren agindu propioz dihardueen sentimen defentsiboek hutsune intentso bat helarazten eusten, zeina bardin izan zeitekeen inguruaren ihes totalaren ondorio edo urruntasun aliatuen mehatxu. Ez neukan astirik ez predisposizinorik gertatzen ari zen nitaz-gaintasuna ulertzeko. Kanporaketako unerik ebazgarrienean ez neban neure helburutik distraitu gura. Oholtzako eskilarak igon eta gomuta sensitiboa daukat zelan puntua jartera zihoan aurkezleari, irribarre ongura-tsuz eta esku zeinu mantendu batez, apur baten itxaroteko eskatu neutson, arnasa hartzeko. Bestela be egoera atezuek badakie arnasa estutzen, baina egun haretan oso bide luzea, amaibakoa egin jatan, identifikatu ezineko astuntasun bat ekarri ezinez, eskilarak astiro igon nebazen, ez nenkien garbi zergaitik, eta nahi be ez neban esplorazinoetan sartzerik.

Kartzelako lana amaitutakoan, jesarri nintzen eta, ondo ala txarto, egun haretako lanak amaituak ziren. Aurkezleak hurrengo izena deitu eban, Altuna azpeitiar gaztea. Hau pilotalekuan agertu zeneko, egundoko txalo zaparrada abiatu zen. Gaztea, barria eta aurreko kanporaketetan ezustea emona izanik, bidezko eta eskergarri iruditu jatan mutila animatu gura izatea. Hurrengo Gorrotxategi zetorren eta, hau be bardin txalotzen ebela ikustean, burua makurtzen hasi nintzen. Ondoren Telleria, Peñagarikano, Lopategi eta Azpillaga. Danak izan ziren eskuzabal txalotuak. Ondorioa errebokatzeko edo behintzat airean izteko seinale desiratuen epea amaitutzat emonik, neure barruari esan neutson: «Bakarrik tiretu bik'ok! Hemen etxaok hiretzat lagunik». Neure morapiloa isilean pasako neukeen, inori esanda, afektatu

egin zaituela zabaltzea besterik ez baita lortzen, kanporanzkoan komunetan Mungiako lagun bategaz topo egin eta esan ez baleust:

—Hemen zer pasetan dok, ba? Kartzelatik urtekeran iñok txalorik bere ez?

—Hori jjiñoat, ba, neuk be! Hemen zer pasetan dan!

—Hastekotan egon nok, baia neu bakarrean bere, enok atrebidu.

—Ez hai nahibagetu. Ondo jjattortek, ze borondate dabillen jakitteko.

Idiazabalgo txalorik eza alde baikorretik ulertzeko bidea Lopategik emon eustan handik urte pilo batera. Herri batean aizkolari, harri jasotzaile eta holakoak ziren eguerdian. Herri gehien bat erdalduna izanez ganera, euria abiatu eban eta aterkinak zabaldu ziren. Jaialdia bertsolarion saio bategaz hasi behar zen. Labur egitea pentsatu genduen, zer giro eta entzule mota izan zeitekeen kalkulaturik. Amaitu dogu eta ez da bape txalorik entzun. Lopategik dino: «Exitu totala! Iñok etxok protesteu!».

Idiazabalgo egitekoak amaituta, hartu neban gertaeraren kontzientziak egun hartako lanari ezin eutson zorionez eragin eta hurrengorako mentalizatzeko eta berkementzeko astia eukiko nebala pentsatzeak lasaitu egin ninduen, pozterik ez bazen be. Arrastian beste zortzikotearen saioa zen eta, Etxegaraten bazkaldurik, entzule gisan jesarri ginen. Han be, bidezko zenez, bertsolari guztiak izan ziren txalotuak, kartzelatik oholtzara bidean. Egun guztian eta etxeranzkoan ezin izan neban gorgoila morapilotik libratu.

## TXALO BARIK SARRITXO

Garai haretan, behin baino gehiagotan gertatu jatan, besteei txalo joten jaken zenbait okasinotan, ni hain barik gelditzea. Oholtzan jesarrita gengozela, gaijartzaileak izenak banan-banan aurkeztu



ebazen. Erdian egon ezkero, zaila da publikuaren portaera bidean aldatzea, baina sarritan ertzean aurkitzen nintzenez, inoz gertatzen zen aurkezlea hastea: «zuen eskuinetik ezkerrera, Xabier Amuriza...» eta danak geldi. Bigarrenetik aurrera danentzat zegozen txaloak. Ilaran aurkeztean, kasu hau zailagoa da, baina beste bat nahikoa sarri gertatzen zen. Bertsolariak deituak izan eta oholtzera igotean, entzuleek txaloaldi orokor bat jo ohi dabe. Gero aurkezleak, tokian tokiko bere sarrera hitzak eginik, bertsolarien izen guztiak jarraian esan daikez, bakotxari txalo joteko tarterik lagatzeke, eta ondoren, agur bana eskatu, honela: «Zuen ezkerretik, betor agurra kantatzera Urlia». Hau mikrofonora doala eta bardin hurrengoetan, batzutan jenteak txalo egiten dau, bertsolaria animatzeko, eskuak berotzeko, edo zaratan parte hartzeko. Beste askotan, eta tokien arabera, erreakzino hori ez da abiatzen. Baina gertatzen zenean, eta nire txanda heltzean, isiltasun totala egiten zen, jentea ikaratu baneu lez. Ikaragarritasuna hein batean gradu bat izan daiteke, baina une urdurietan, (bat-bateko bertsogintzan, batez be hasieretan, beti dago tentsino puntu bat, batzutan oso nabarmena, norberak be zergaitik ez dakiena), seinale guztiak esanahi okerrenetik ulertzeko joera izaten da eta pentsatzen neban: «Hemen etxaok ni animetako gogorik». Eta desanimatu egiten nintzen zeharo. Normalean agurra pentsatu samarra izaten denez, hori ez eban desanimuak baldintzen, baina ondorengo saioa, indartsu nahiz makal nenbilela, noz amaituko egingo neban.

Norbere buruagazko inpresino negatibo batek, nahizta neurri handi batez oso pertzepzino subjetiboak direla jakin, eragin handia dauka gogo-aldartean, nigan behintzat eta bat-batean nabilenean. Bertso jarrien edo kantatuen emonaldietan, seinale ustez kontrakoek ez nabe askorik afektatzen, («Lasai! Neuganduko zaittuet!»), segurrenik kontrakotzat be interpretatzen ez dodazelako, baina bat-bateko saioetan, urte hareitan, narrua jareindako subea baino sentiberago nengoen. Nik ez neban entzuleakan prekauzinorik sortu nahi, ezta errespetorik be, sinpatia baino,

eta hori oso gatx jarri jatan. Gaur oso beste era batera bizi dot bertsolaritza. Ez daukat orduko erantzukizunik, zirkuito nagusitik kanpora samar nago, entzuleria aldatu egin da, neu be apur bat lotsabakotu eta zitaldu egin naz, motibo horreikaitik sufritzeko ardurarik ez dot hartzen eta, jakina, okasinoak be asko gixitu jataz. Orain ez naz txapelduna, samaldako gregario bat baino. Zulo betetzaile bat.

Jaien amaierako herri afaria. Musikariez ganera, bertsolari bi ginen programan. Iritsi nintzenerako, eskoletako jantoki handia beterik zegoen eta jente gehiena bere tokian jesarrita. Sartu nintzen, antolatzaileakaz eta parean gertatzen zirenakaz ohiko berbak egin nebazen eta agindutako tokian kokatu nintzen. Dana normaltzat joko neukeen, ingurukoakaz gizalegezko kaixo eta zer barri niharduela, oso minutu gitxira, ia segian, beste bertsolaria agertu ez balitz. Hau jantokian sartuz batera, sekulako txalo zaparrada sortu zen, jesarrita zegozen asko zutundurik. Hari eta niri egindako harreren konparazino inebitableak ikaratu egin ninduen. Bera aurretik etorria izan balitz, ez nintzen diferentziaz ohartuko, baina destinoak gertaeren ordena alderantzizkoa gura izan eban eta aulkian josita geratu nintzen. Gau deprimitua igaro neban, gertatuaren abstrakzinorik lortu ezinda. Kantuan be urduri eta dana beharrean ibili nintzen. Laguna konturatu zen, antza, eta ez eban nire ahultasuna ebidentzian izteko aukerarik galdu nahi izan. Gau haxe izango zen, kontrako zirkunstantzien pilakuntza bat bide, behinola bertsolaritza lagatzeko ausardiarik ez izanaz akusatuko ninduenetako bat.

## DURANGOKO EMAKUMEAK

Larogeta bira itzulita, finalerdia saio bitara izanik, bigarrena Durangon jokatu zen. Han be gertatu jatan, edo gertarazo neban, ezbehar txiki bat. Peñagarikano eta biok egokitu ginen zortziko txikian. Gaiak zinoen: «Ezertarako ezagutzen ez zaituen neska honek, Peñagarikanok, telefonoz dei egin dizu, Amuriza». Peñagarikano hasita, saio hauxe egin genuen:



### Peñagarikano – Amuriza

1)

*Jakingo al det nola*
*dantzatu mingaina*
*hemen naukazute ni*
*zein neska liraina.*
*Xabier gustatzen zait*
*neri alajaina*
*ez det ezertarako*
*ezagutzen baina.*

2)

*Telefonotik hartzen*
*dut usain beroa*
*baina burutik hago*
*dexente eroa.*
*Hi ez haiz nik maitatzen*
*dudan jeneroa*
*emaion beste bati*
*hire panderoa.*

3)

*Ze kontuk telefonoz*
*esaten dituna*
*ikusten danez ez da*
*neretzat laguna.*
*Xabier Durangon be*
*hain da ezaguna*
*mezako hura baino*
*whisky naio duna.*

4)

*Neska honek dakarkit*
*gauza betikoa*
*ez uste naizenikan*
*hain txoropitoa.*
*Erosi zan iturri*
*automatikoa*
*hire jardinerako*
*hori dun nahikoa.*

5)

*Ez da etorriko ez*
*nahi ez dan ekaitzik*
*ta nik ez det baztartzen*
*praile ta apaizik.*
*Eta ez diot opa*
*inolako gaitzik*
*ni maitatzea eta*
*ezkontzea baizik.*

6)

*Telefonoz ari zait*
*neroni antsika*
*hori ez da lekua*
*jotzeko musika.*
*Hortik ibili gabe*
*hola garrasika*
*etor hasi bistara*
*gonak erantzita.*



7)

*Xabier honek dauka*
*jenio berua*
*zorroztu nahi luke*
*bere plumerua.*
*Bistan erantziko det*
*nere kulerua*
*nahi al dezu zuk busti*
*nere florerua?*

8)

*Nago floreru hori*
*busti beharrean*
*oraintxe jarri naute*
*trantze ederrean.*
*Oraindik hortarako*
*nago indarrean*
*ujola izango da*
*ilunabarrean.*

Saio hau eta beste guztiak zelan joan ziren kontzientzia argiegirik barik, Ezkurdi pilotalekutik pozik urten neban, finalerako sailkatu nintzela-ta. Kanporantzean batak hau eta besteak hori esanez, eta batari hau eta besteari mau erantzunez noala, frontoi aurreko karrerapean kazetari lagun batek dinost:

—Uste diat endreduren bat etorri behar zaiala.

—Niri? Zer dala-ta?

—Emakume talde bat hor bilera antzean ikusi diat. Gauza garbirik ezin izan diat ulertu, baina oso haserre ziruditean, zerbait egin behar zela esanez.

—Asko dok, ba! Hori be bajjekuk? —Eta pentsatu neban: —Peñagarikanogaz eiñiko saijjoaittik ixeng'ok.

Pentsamentua buruko bihurguneren batean martxan geratu zen, baina une haretan ez nengoen arreta eguneko untzetik aldatzeko moduan. Handik egun batzutara gutun bat hartu neban, gogorra, garratza, mingarria. Anonimoa zen eta pentsatu neban: «Ño! Geuzie etxaok olgetako! Ez haz urriñekoa ixengo, baia akusaziño guztijjok hobeto emongo jjeunen ixen da guzti». Goiz batez, finalaren aurreko astean, neure EGINeko lantokira heldu nintzenean, zurtz eginda geratu nintzen, eritxi sailean honako artikulua, anonimoa hau be, ikusi nebanean:

*Eskutitz idekia Xabier Amurizari*

*Kaxo Xabier: Durangoko Ezkurdi aretotik nator eta gehiago gabe, lerro hauen bidez zera agertu nahi nizuke:*

*Nire iritziz, bertsolaritza Herri baten kultur agerpenetariko bat da. Bertan haren sentipenak eta baloreak agertzen dira bertsoen bidez. Euskal Herriarenak, hain zuzen, kasu honetan.*

*Zu zaitugu Euskadiko bertsolari txapelduna, beraz, zure erantzukizuna arlo horretan goi mailakoa deritzat, euskal kultur manifestapen horren ordezkari zarenez gero.*

*Zuk hori ederki zaintzen duzu eta sentsibilitate bikaina agertzen ere, zeure aita zenari buruz abesten duzunean (txapela irabazi zenuenean Donostin ikusi genuen), edota Ameriketara doan euskaldun baten lekuan jartzea gaiak eskatzen dizunean. Gaur arratsaldean ederki moldatu zara, zeure abertzale printzipioak txantxetan ere apurtu gabe bertsoak moldatzeko.*

*Bertsolaritzan eta bertsolaritzatik at, euskal kulturari bultzada ematen saiatzen zarena guztiontzat ezaguna da. Gizon argia, ikasia eta abila zarenik ez dut uste inork uka dezakenik.*

*Aipaturiko dena horrela izanik, pentsa dezazuke gutxiena espero nuela zure ahotik emakumeori buruz entzun dudana nire belarrietara sartzea. Munduan ez da hitzik, sentitu dudana agertzeko, zure emakumeontzako mesprezua eta gorrotoa goitikatu duzunean. Bai, Xabier, bortxaketaren «apologia» egin duzu gaur. Eta lasai lo egingo duzu, poliziak atxilotuko zaitun beldur gabe. Gai horretan berdin pentsatzen bai duzute. Eskemak apurtu dizkidazu. Uste duen Euskadi libre bat lortzen denon artean saiatu behar genuela, baina denok (emakumeok ere) askatasunean eta eskubide berdinekin bizitzeko. Eskubide hoietan sartzen nuen denon askatasuna, geure sentipenak agertzeko. Nola emakume ala gizonezko, elkar maite dugula agertu eta maitatzeko ere. Zeuk diozunez, horretan ausartzen den emakumea «panderoa» jo, «gonak kendu» eta bortxatu egin behar da. Bejondeizula. Bokassa afrikarrari entzuten negoela uste izan dut. Ez da makala eraman izan dudan muturrekoa. Euskaldun «progresistak» beste maila batean zeundetela uste nuen benetan.*

*Besterik gabe, bada ez bada ere, kartaz agurtzen zaitut, ez bait nago prest zuk niri panderoa jo dezaidazun (telefonoz deitu zaitudalako), ezta ere gonak kendurik zure aurrean jartzeko, sentitu dudana agertzearren.*

(EGIN, 1982-12-10)



Irakurri nebanean, larritu egin nintzen: «Honixek lorrindu bi'stiek finala! Holakoxe polemikie bi'naijjoan ointxe, trankil ibiltteko!». Neure mahaian oso mindurik, sastaturik geratu nintzen, nonondik ager zeiten desio neban erreakzino baten zain. Publikoki eta era haretan zabaldurik, artikulua edur-bola baten hasieratzat ikusten neban, finalerako auskalo noraino eta zer norabidez handituko zena. «Geldi, hi! Eutsi buruorri! Eik heuk gur'oana, baia lokatu barik». Artikuluaren egia ala guzurra, arrazoia ala gehiegikeria, ez zen niretzat hain prioritarioa orduan, finalari begira neure gogoa kontrolatzea baino. Ezin neban permititu kemenean eraginda joaterik, horrela galduta bainengoen. «Geldi, hi! Badekok astijje. Itxijjok mundueri dabillela berak gure deuen moduen da hik eutsi burueri tente».

Lehenik alderdi mingarrienetakoa egin jatan zelan anonimo ha argitaratu zen lanean niharduen egunkarian bertan, neuk ezer jakin barik. Ez dinot argitaratu behar ez zenik, nahizta izen

gordean halako salapenak zabaltzeari ez dautsodan zindoegi eritzten. Ez zen horregaitik. Baina gitxienez, neu egunkariko lankide izanik, ohartuazo behar eusten, honako zerbaitez: «Hi! Hemen hire kontrako artikulu bat iritsi zaiguk. Hauxe eta hauxe ziok. Argitaratzea merezi duela uste diagu, baina jakitun egon hadin deitzen diat. Zer iruditzen zaik?». Honelako zerbait gertatu izan balitz, mentalizatuago aurkituko nintzen, baina norberak orriak betetzen dituen egunkarian, goizeko lehen begiradan, halango mailukada hotz-hotzean hartzea ez zen, ez, lankidetzaren etsenplu samurra. Etxean bertan traditurik sentitu nintzen. Egunean bertan artikulu hauxe idatzi neban, bihamoneko eritxi sailean agertu zena:

## Barka gaizki esanak

*Kaixo M.A.A.: Atzoko EGINen «Eskutitz irekia» bidali didazu. Durangoko bertso saioan eskema guztiak apurtu omen nizkizun. «Emakumeontzako mesprezua eta gorrotoa goitikatu» omen nuen. «Bortxaketaren apologia» egin omen nuen. «Bokassa afrikarrari entzuten ari zinela» uste omen zenuen.*

*Urrunegi joan zara, laguntxoa. Badakit deskuidatu nintzela. Zure eskutitza irakurri aurretik, mina harturik nuen neure barruan. Zuk min hori berritu egin didazu. Haunditu ere bai, egia esateko. Arrazoia duzu, baina ez hain konklusio gogorrak ateratzeko.*

*Lehenbizi esan behar dizut ez nuela gaia ondo ulertu. Txapelketan ez da gutxitan gertatzen hori. Neska ezezagun batek deitzen zidala entzutean, tentatzeko deitzen zidala edo halako zerbait ulertu nuen. Bertsolariak, gaia entzunez batera, efektu batzuk lortzera jotzen du. Kontraste batzuk sortzera. Horretan ez dira beti norbere gogoko argiak pizten buruan. Zuk aurpegiratzen didazuna etxean eginiko bertso jarrietan bota banu, merezia nuke zure eskutitza. Baina bat-bateko bertsoetan, txapelketan batez ere, buruak ez du etxean bezala funtzionatzen. Neu ere gero, neure barruko minean, harriturik nengoen nola palu hartatik hainbeste ekin nion. Bertsolariari sarritan gertatzen zaio sentitzen ez duena esan beharra edo esan nahi ez lukeen moduan esatea. Esan du, baina «atera» egin zaio. Saio baten ondoren, ez al duzu inoiz bertsolaririk buruari helduta ikusi? Zerbaitegatik azken agurretan maiz entzuten da: «Gaizki esanak barkatu». Formula bat baino gehiago da hori.*

*Horrez gainera, bertsolaritzak, beste edozein sailek bezala, inertzia eta karga haudiak arrastatzen ditu. Saio batean inertzia guzti hoietaz libratzea ez da beti gertatzen dena. Txapelketan gutxiago. Nik kantatu nituen bertsoak beste norbaitenak izan balira, ez zenion agian eskutitz hori idatziko. Horretan eta beste arlo batzuetan ere, niri gutxiago barkatzen zaidala badakit. Ez dakit hori pozteko ala penatzeko motiboa den. Lasaiago ibiltzeko ez behintzat. Bestela ere banuen nahiko kontrario. Orain zurekin bat gehiago. Bakarra bazina, pozik gainera. Baina bildur naiz ez zarela konklusio horiek atera zituen bakarra izango.*

*Zuk, zeure sentipenak dramatismoz bueltatzeko, tranpatxo bat egin didazu: auzia pertsonalizatu egin duzu. Baina «zuk» ez zenidan niri telefonoz deitu eta, deitzen badidazu ere, ez dizut halakorik esango. Zeuk ere ez zenuen gaia ondo ulertu, ni baino lasaiago egongo zinen baina. Nik zure haserrea onartzen dut. Zuk aina estimatuko nuke motiborik eman ez banu. Baina konklusioetan urrunegi bidali nauzu: «Afrikako Bokassaren» ondoraino! Zaude lasai, «bortxatzaile» deklaratu banauzu ere. Txapelketan gabiltzala, ez uste hortarako ere gogorik sobratzen zaidanik. «Eta lasai egingo duzu lo –idazten didazu —, poliziak atxilotuko zaitun bildur gabe». Ez dakizu ondo txapelketa zer den, lasai lo egiteko. Poliziena barkatzen dizut, beharbada zuri baino sarriago etorri zaizkit baina.*

*Azkenez, eskutitz hori benetan eskertzen dizut, zure antzeko konklusioak atera zituzten guztiei erantzuteko aukera eman didazulako. Esandakorik sinesten baduzu, barkatuko didazu. Sinesten ez baduzu, alperrik eskatuko dizut barkamenik.*

Erantzun honek, gaur irakurrita, apur bat lotsatu egiten nau, larregi apaldu edo makurtu nintzelako. Egia da gaia ez nebala zuzenegi jaso, hor ninoen lez. Nire burutik «neska ezezagun

batek telefonoz tentatzen zaitu» edo horrelako zeozer pasatu zen, Pañagarikanok be abiadako bertsoak «Xabier gustatzen zait neri alajaina» kantatu eban eta, kontra egiteagaitik, gordintasun gratuito samarretik jo neban. Hurrengo egunetan, irratian-edo entzun da, neska ezezagunaren deia markabagea izan zela ikustean, min hartu neban, intentzino tentatzailea neure garaun urdurien traizinoa izan zela konturatu bainintzen. Hortik aurrera, bertsoak ez dira, noski, harrotzeko modukoak, baina ezta polizia etxera bialtzekoak be. Auzia freskura handiagoz hartu izango neban, finalaren zama ganean euki ez baneu. Bildurtu egin nintzen eta etsaigoak zeozelan leundu gura nebazen, errukira deituta bazen be, edur-bola posibleak aurrera egin ez zegien, ez bainenkien zer alkantzuko kanpaina zegoen anonimo harein azpian. «Finalera pankarta salatzaille ta guzti agertzie besterik etxoat biher!». Artikuluak eta nire erantzunak, nire inguru hurbilean, zeresan handia zabaldu eben. Banenkien ez zela mundua haretaz obsesionatzeko kontua, baina, pertsona bakotxak bizi dauen mundu txikian, batez be nonondiko erasoaren alertan dagoenean, haxe zen, egun hareitako nire kezka nagusietakoa, edonon aitatzen baiteusten: «Zer? Aixkidetu haz emakumiokaz?».

## FINALEAN BARRIRO «EMAKUMEA»

Gai honi dagokon unerik larriena finalean bertan etorri zen. Eguna bazihoan aurrera, ustez ez nenbilen txarto, eta lanen gailurtzat kartzelako gaia falta zen. Handik bueltan iritsi nintzen, ohi den tentsinoan eta ahalik kontzentrazino handienean, eta lehenengo lantzat, hamarreko txikian, azken puntua emondako bertso biak kantatutakoan, entzuten dot: «Amuriza! Hiru bertsotarako hemen duk gai haundi eta eder bat: EMAKUMEA». Buruan mailukada bat emon baleuste, ez nintzen durdituago geldituko. Lehenengo pentsamentua: «Hortxe jjaozek!». Durangoko emakume-



ak, alegia. Bigarren pentsamentua: «Gai hau neu ixorretako ipiñitte jjaok». Hirugarren pentsamentua: «Jaurti toaillie ta erretireu hai!». Laugarren pentsamentua: «Ez eik alperreko pentsamentuetan denporarik galdu. Hasi ein bi'ok!». Pentsamentu honeik zeozelako segida baten disponitu dodaz, ez baitago beste era batera idazterik, baina danak batera lehertu ziren nire buruan. Banan izatera, ezingo nintzen garaiz ailegatu. Bederatzi puntuko laburrean egitea pentsatua neukan eta neurri horretan, gaiari gerri sozialetik helduta, azalpen egokiak garatzeko modurik ez neban ikusi, bestela be nahiko zailtasun baitauka. Beste neurri baten bila hasteko unea be ez zen. Kantatzen hasi aurrea ez da zalantzak argitzeko parada. Gaiari aurrez heltzea deskartaturik, «ama» bururatu jatan eta ez neban zalantzarik izan bertatik hasteko. Hona, larritasun haretan, amari kantatu neutson lehen bertsoa:

*Emakumea esanda*
*esana da dana*
*emakumetan bada*
*bat txit bakana.*
*Irratian han dago*
*sortu ninduana*
*Baldatikan oraintxe*
*noa beragana.*
*Aita dut joana*
*hau pena dudana*
*baina haren dama*
*bizirik dut ama*
*hauxe da poza bertsoz*
*ezin emana.*

Gaiaren trataera bindikatzailetik apur bat saiheska bada be, bertso hauxe da neure bizitza guztian kantatu dodan onenetakoa. Ondino ez zegoen telebistarik eta Baldan ez zegozen bertsozaleek irratiz jarraitzen eben. Gure ama be hantxe imajinatzen

neban (ez zen irudimen handirik behar), bere pilazko irrati baltzuska ezkaratzeko mahai ganean ebala. Antezedente nahasgarri ha gertatu ez balitz, gaiari segurrenik alde sozialetik kantatuko neutsozen hiru bertsoek ez eben beharbada bakar honek beste balio izango. Eztabaida daiteke ez ote jakon gaiari topikoz erantzuten, baina inork ez daust kenduko, indirektoki eta egoera erdi akzidentalean, bertso hau sortu izanaren pozik.

Telebista aitatu dodan ezkero, ondorengo desenpate saioan gai hauxe ipini euskuen, zortziko txikian egiteko: «Lopategi eta Amuriza telebisioaren aurrean zaudete. Hik, Lopategi, lehen kateko programa ikusi nahi duk eta hik bigarrena». Euskal Telebista laster ikusi ahal izateko zaratak bazebizen arren, orduan ez zegoen Madrilgo kate biez beste telebisinorik eta gure etxean haxe be ez, ez baitzegoen aparaturik. Gaia entzunez batera, ezelako erreferentziarik aurkitu ezinik geratu nintzen. Derrigorrean agertu ziren «Iñigo» eta «Hermida» espetxe garaitik geratu jatazen hondakinak ziren, jarraitzen ebenik be ez nekienak. Lopategik be apenas zeukan orduko telebisinoaren ezagutza handirik eta haxe izan zen lehorrean mosuger egin beharra. Eskerrak berari Euskal Telebista aitatzea gogoratu jakona! Antzeko trantzeak bertsolaritzan maiz jazoten dira eta eginkizun ohikotzat hartu behar da informazinorik ez daukazun gaietan be defendatzen jakitea. Dana dala, ez da oso egintza berogarria hutsetik putza atarraten zabizela sentitzea.

## NAUFRAGOAREN «BALDARRA»

Gero kartzelako lanean naufragoaren gai ospetsua etorri zen. «Hi naufrago bat haiz itsasoaren erdian, ohol baten gainean. Badator itsasuntzi bat, ikusten hau, eta aurrera segitzen du». Nire izenari lotuta geratu den eta ni hari lotuta geratu natxakon saio honeri buruz, ezin dot aitatu barik itzi gogoratzeak ondino be dardara damostan larritasun bat. Lehen bertsoan hutsaren izpi bategaitik ez nebn poto egin. Susto ha, jakina, ez zen «emakumea» entzutean lakoa, zeina kanpo faktoreekiko erreakzinoa izan zen. Naufragoarenean, bat-batekoaren barne kinka bat izan zen, deskuidotik mirariz libratu zena.



*Itxaso hori dago zatarra*
*nire ohiua eta negarra*
*untzi bat horra nun azaltzen den*
*nik behar nuen izarra.*
*Oraintxe sartu zait harra*
*berriz piztutzeko garra*
*baina hau da zoritxarra*
*ikusi naute aurrean eta*
*ai hau destino baldarra*
*laguna ondotik pasatu eta*
*nik hemen ito beharra.*

Azken aurreko puntuko «baldarra» horreri arretaz erreparatzen dautsona laster ohartuko da ez dela halako une eta kontestuan oso kalifikatzaile egokia, baina berari esker salbatu nintzen ahoa betean kantatzera ninoan «ai hau destino zatarra» naufragiotik. Amai ondo erabagiaren eta ustez biribilaren atari-atarian, eta artean ahapaldia indartsu nekarrelako sentsazino berotuan, ez dakit buruko zein zirritutatik, duda izpi batek nire zelai mentala zeharkatu eban, bat-bateko konmozinoa eraginez, «zatarra» ha esana ez ete neban. «Zakarra» esan neikeen, baina ez nengoen ziur bietariko zein neban kantatua. «Zantarra» esan neikeen, baina berba hau, bizkaieraz oso esanguratsua izan arren, bestearen bardintzat jo zeikien, pototzat, beraz. Pentsakizun guztiok duda izpiaren abiaduragaz batera gertatu ziren eta arriskua zelan gaindituko, «baldarra» otu jatan eta berau joan zen aurrera, adjetibo «baldar» samarra iruditu bajatan be. Nik destino kru-

dela, bihozbakoa, zitala esan nahi neban, «zatarra» hain zuzen. Segundo batzuk lehenago konturatu banintz, aurkituko neban berba egokiago bat, edo esamoldea beste era batera osotuko neban, baina ohartu nintzen unean ez zegoen rektifikatzerik. Harrezkero gehien estimatzen dodan hitza «baldarra» haxe da, berari zor baitautsot bigarren txapela. Poto ha burutu izan baneu, nire txapela hantxe joan izango zen segurrenik, ez potoagatik bakarrik, haren ohartzeak edo zalantzak, hurrengo bertso bietarako desfondatuko ninduelako baino. Ai Baldartxo, Baldartxo! Hire kasuan, nigazko behintzat, egia don izaki apalak direla maitagarrien.

Nonork pentsa leike zer daukan adjetibo horrek txarrik. Beharbada deskuidoaren aho-ahotik itzuliazo ninduelako eta pentsatua neukan konnotazinoagaz bategi begitandu ez jatalako juzkatzen dot horrela. Badakit bat-batean hori baino laxoago jokatu behar dela, baina hemen be berbek euren adierazmen berezkoa eta kontestuala dauke eta errimatzeagaitik ezin dira edozelako asoziazinoak egin eta, egiten badira, balioa galduazoten dabe. Batez be bertso jarrietan ez dago bat-batean parkagarri diren lizentziak aplikatzerik, zerbaitegaitik baitago zuzentzeko eta hobetzeko astia. Destinoa, haretaz daukagun kontzeptu txarrean, izan daiteke gaiztoa, zitala, krudela, lazgarria, kupidabakoa, parkatzailea, itsua, tiranoa, makinala, inexorablea, sadikoa, mendekatia, anikilatzailea, fatala... nahi dozun guztia, baina nekez har daike «baldarrak» emoten dauen abandonu eta ezaxol kutsurik. Beste kontestu batean baleiteke hori be eukitzea, baina kontestua prestatu egin beharko litzateke. Destinoari suposatzen jakon zorroztasun inplakableagaz ez dator bat deskuidatzeko ahalmena, ni zorian egon nintzen lez. Urteak joanda be ezin dot hotzikarak jo nagien ekidin, nire historiala instant baten eta berbatxo baten gorabeheran egon zela pentsatuz.

Finala amaitu eta gero, beste anonimo bat agertu zen, lehengo M.A.A. berak bialdua, (EGIN, 1983-1-7), non zinoen, kar-



tzelako gaitzat «emakumea» emon euskuen hataz: «Oraingoan, ordea, aukera ederra zenuten, zabal emakume hitzak zer burura arazten zizuten agertzeko. Eta ikusi genuen, Enbeita eta batez ere Lopategi kenduz gero, beste denok zer esan zenuten». «Zenuten» hori eta beste «zuek» guztiak batez be neugaitik ziren, jakina.

Artikulu hau patxadatsuago hartu neban, txapelaren babespetik. «Oin esaixue gur'ozuena!». Ez neban erantzuteko nekerik hartu. Oso egun gitxitara jakin neban nortzuk izan ziren gutun eta artikulu bialtzaileak, oso ezagunak eta ustez (nire aldetik behintzat) lagunak. Gatazka haren azpian dagozen eta inondik be ukatzen ez dodazen auzi doktrinalez ganera, bazen ñabardura koiunturalago bat. Anonimo harein jabeek ez eben gura nik irabazterik eta uste dot badakidala nor gura eben txapeldun, baina bata animatzeko, ez dago bestea hondatzen saiatu beharrik, batez be beti lagun itxura egin izan jakona bada. Izan ziren mogida haretan gaiari emondako publizitate eta termino gogorregiakaz bat ez zetozen feministak eta halantxe jakin neban, neu bape bila joan barik. Beti dagoz, kritikatu behar bazaitue be, karino apur bat dautsuenak.

Igaro nebazen sustoak eta gatazkak igarota, bigarren txapela jaztearen poza azaldu beharrik ez daukat, edonork irudika baitaike. Halan be, lehen txapelaren aldean, poz trumilduagoa, apurtuagoa izan zen. Larogeikoa urjauzi espontaneoa izan zen, malkartasun barik ganezkatua, ondorengo erreakzinoez jabetzen hasi arte. Larogeta bian eskarmentaturik nengoen eta banenkien artean konkistagatx nebazenak txapel bat gora behera ez zirela errendituko. Alde horretatik, neurez nahiko ameskorra izan arren, bigarren txapelak ez eban nire ilusinoen eremurik zabaldu, aurreko posizinoak gotortu baino. Alegia, honako arrazoibidea moztu: «Ikusten? Joan beharrekoak joatea nahikoa izan duk, horren balioa agerian uzteko». Bigarren txapela, beraz, oso pozik, baina oso defentsiboki hartu neban, neure gogoa ilusino barrien gatxetik prebenituz, batez be ondorengo lehen astea ikusitakoan.

## Barriro zaputza

Trebiñotarraren zortzigarren bertsoko «argitu behar ditiat —nion— lau egi eta bost begi» pasarte honek adierazoten dau zelako gogoa gelditu jatan zenbait gauza kontatzeko. Zeintzuk ziren bigarren txapelaren pozak, zeintzuk bildur eta oztopo izan nebazen, dana gaindituta ikusteak zelako jabaltasuna ekarri eustan eta honelako kontuak neukazen esateko. Baneban orri idatzi bat be, neure ideiak eta bizipenak era ordenatuagoan azaltzeko. Gogoan daukat zelan pentsatua neukan esatea nire pozik handienetako bat bertsolaritza guztian bat-bateko bertsolaririk gorenetakotzat joten neban Lopategiren aurretik geratzea izan zela. Emakumeakazko istilua, txapelketan agertu zen gazteria (Sebastian Lizasoren eta Peñagarikanoren lehen finala), anekdota batzuk... hainbat gauza neukan esateko. Pozik nengoen eta berba egiteko gogoz.

Neure apunte papertxoa eskuan nebala, astelehena, ohiko lanak eginez, deien zain igaro zen, irrati, egunkari, aldizkari eta abarretatik (ondino Telebistarik ez zegoen) itxaroten nebazenak. Eguna inondiko dei barik amaitu zenean, susmotxartzen hasi nintzen. «Nori erantzutekotan najjaok ni, iñok deitzen ez bajjok?». Martitzena, eguaztena, aste osoa joan zen eta, bertsoak dinoen baizen literalki:

*Hara non gero ez aldizkari /irrati ez egunkari*
*inork ez zidan hitz bat eskatu /hau ere nahiko marka,hi!*
*Trebiñotarren legena edo /biraoa ote da hori?*

Eskarmentaturik nengoelakoan, haxe ez neban inondik itxarona. Nik uste neban batetik eta bestetik deiak izango nebazela, alkarrizketak eskatuko eustezela, lehenengo txapelketa ondoren lez, ustez zerbait inportantea irabazi dauenak itxaron daiken lez. Uste neban... Oh! Txarto egin al neban, gehiegizko pretentsinoa al zen euskal medioetatik behintzat zerbait itxarotea? Kaixo bat, zer moduz bat, zelan lo egin dok, huskeria bat! Umilazinoa hainbat sakonagoa izan zen, neure burua, apunte eta guzti preparatua, inoren interesik ezera hain barregarriro esponiturik aurkitu nebalako. Ustez azaina baten egilea, txalo bila balkoiratua, inork ez dautsola begirik jaso ikustean, burua besapean gordeta erretiratzen den moduan, zerualdera begirada aditu bat jaurti ondoren, hegaberen iragaitza hauteman baileuen. Hegabera ederra hago, bai! Apunte paper lotsagarria zati-zati eginda komunetik bota aurretik, jatekotan be egon nintzen, halako lotsariaren zantzurik inon ez iztearren, baina egun bat gora behera, gehiago edo gitxiago transfiguraturik, zulo beretik ezkutatu beharko ebala pentsaturik, saneamentu tripazikinaren ilokalizazinora jaurti neban neure zaputza. Danen alkar hartze beligerantea suposatzeko aztarnarik izan baneu, fronte baten aurka burrukatzeko urguluan kontsolatuko nintzen, baina desplantea ondo enkubriturik zekarren kointzidentzia inpentsatuak inoranzko ekimen barik izten ninduen. Leitekezen ulertze ahalegin guztiak egin arren, ez jatan inondik koadratzen, Euskal Herriko txapelketa baten ondoren, zelan ez eban inork, inortxok be, txapeldunari berba erdi bat eskatzea pentsatu. Ez naz dei pertsonalez ari, komunikabideez baino. «Hostia!! —pentsatu neban —. Hemen jjabik morapilloa!». Iragan posibleen alde sama jokatzerik ez dago, baina susmoa daukat, irabazle gertatu ez banintz, alkarrizketa ugari izango nebala. «Zer sentitzen da txapela galtzean? Nola ikusi duzu txapeldun berria? Nola giroa?»... Eta abar. Lehenengotan txapelaren jabetzak edozein oker menperatzeko adorea ematen dau, baina denporaz, ezabatuz doan poztasunaren hutsunerantz, zure garaipenaz inor gitxi poztu izanaren goibeltasuna altzetan da.

# 9. 86-89-93-97. Txapelketak

## HURRENGO TXAPELKETA

Euskaltzaindiak hurrengo txapelketarako deia egin ebanean, barriro be bertsolarien artean mogida handia sortu zen. Txapelketa antolatzeko era hareri erreparo asko ikusten jakon, bakotxak azpitik izan zeikezen susmo aldeko edo kontrako guztiez ganera. Izenak emoteko epea etorri zen eta mordo batek emon be egin genduen. Bertsolarien artean atzera-aurrera handiak izan ziren, Euskaltzaindiak ez ebala txapelketa zuzen bat garantizatzen eta abar. Azpian, eztabaidako arrazoien artean enuntziatzeko modukoa ez bazen be, oso uste zabaldua zen txapelketako emoitzak, neurri handi batean, subjektu antolatzailearen gorabeheran zegozela. Leku askotatik iritsi zen nire belarrietara, batzutan zuzen eta aurpegira, beste batzutan zeharka, honako hau: «Euskaltzaindiarekin jarraituta, Amurizari ez dago txapelik kentzerik». Beste arrazoi jator eta desinteresatuago batzuren artean, paperetan agertuko ez den azpi-arrazoi hau ez zen ahulena izan, antolakuntzaren esku aldatzea ulertzeko.

Izenak emoten hasi ginen, baina burdia geroz karrankariago zihoan eta behin gogoratzen naz zelan esan neban mogida haretako buru zebilen talde batean: «Zeren edo noren kontra ari gaituk hemen? Txapelketa Euskaltzaindiak antolatzen dik, geuk bertsolariok antolatzeko potrorik ez daukagulako». Ez, noski, nik esan nebalako bakarrik, baina txapeldun bigentea nintzen aldetik, nire hitzak bere garrantzia izan eban, batez be bertsolarien kolektiboak hautatutako ereduaren alde duda barik jarriko nintzela garbi itzi nebanean. Txapel biren jabe izateak interes

pertsonalei ez begiratzeko askatasuna zemostan. Han eta hemen hamaika batzar egin ondoren, azkenean erabagi historiko bat hartu zen. Bertsolarien kolektiboak bere esku hartzen eban txapelketaren antolakuntza. Hementxe koka daiteke gero «Euskal Herriko Bertsolari Elkartea» lez izentatuko zen eta orain «Euskal Herriko Bertsozale Elkartea» den erakunde eta mogimentu garrantzitsuaren sorrera.

Euskaltzaindiaren deialdira izenak emonda gengozenok desapuntatu ginen eta batzar askoren buruan, oinarrizko marko bat konformatzen eben hiru printzipio nagusi onartu ziren. Beste erabagi batzuren artean, niretzat honeixek izan ziren garrantzitsuenak:

1) Euskal Herrian zehar bertsolaritzaren presentzia oso ezbardina izanik, eremu nazionala hiru lurraldetan bananduko zen: Gipuzkoa; Ipar Euskal Herria-Hego Nafarroa; eta Bizkaia-Araba.

2) Eremu honein arabera, bertsolarien partaidetzan, hedapen errealaren arabera, Gipuzkoari egokituko jakon portzentaiarik handiena, bertsolaritza probintzia horretan baitago indartsuen, baina helburu politiko eta kulturalak kontuan harturik, beste lurraldeek be presentzia garantizatua izango eben. Portzentaiak eta zehaztasunak ez daukadaz gogoan, baina hor egongo dira nonbait idatzita.

3) Epaimahaia hiru lurraldeetako ordezkariek bardinean osatuko eben. Halan Gipuzkoatik hiru, Bizkaia-Arabatik hiru, eta Iparralde-Nafarroatik beste hiru, guztira bederatzi epaile.

Hiru printzipio honeik oso garrantzizkoak izan ziren eta txapelketaren filosofia bat markatzen eben. Epaimahaiaren proportzinoa finkatzea asko kostatu zen, baina azkenean osakuntza bardinkoia onartu zen, erizpide onez nik uste, bertsolarien ugaritasunak ez baitauka zerikusirik, edo ez leuke euki behar, epaimahaiaren konposizinoagaz.

Txapelketaren diseinuko beste zenbait erabagi txikiagoren artean, bi hartu ziren, nire oposizino guztizkoa izan ebenak. Bata zen aurreko txapelketako lehen-bigarrenak (Lopategi eta ni



neu) finalera zuzen sartzea. Txapelketa bertsolarien eskura ekarri eta arau pribilejiozko horreri arbitrarioa eta injustua eritxi dautsot beti. Eta diferentziak egiten hastekotan, txapelduna eta bigarrena maila berean kontsideratzea be ez jat bidezko iruditzen. Ez dot esango aurreko txapeldunari beherengo mailatik jokatzen hasteko baldintza tentela ipini behar jakonik, baina ezta finalera zuzen sartzeko txartelik be. Erdibide batean, finalerdietan hastearen alde egin neban, baina alperrik izan zen. Zuzentasun kontua alde batera itzita, alde pertsonaletik be ez dot uste batek dana egun bakarrean jokatzea abantaila denik. Aurreko fase bat gaindituta iristeak tenple hobea emon behar dauela iruditzen jat, nahizta bidean gelditzeko arriskua be egon, baina hori ez da arrazoi autorgarria.

Beste erabagi bat izan zen finala zeharo planoan jokatzea, hots, danek lan bera eta batera egitea, ezelako koska progresiborik gabe. Larogeian gitxienez lehenengo bien arteko azken saio bat eta larogeta bian desenpate kontzeptua sartu zen, gero praktikan halantxe gertatu zena, baina larogeta seitik aurrera danek ex aequo amaitzeko eredu astuna nagusitu zen. Eredu honeri zelanbait solidarioago edo taldekoiago izatea egozten bajako be, itxuraren demagogia besterik ez da. Eredu piramidalak, bertsolarien aldetik asumitua izan ezkero, eredu planoaren helburu eta gizabide guztiak bardin-bardin betetzen ditu eta ganera emozinoan, abiaduran eta bariazinoan irabazten dau eta, garrantzitsuena dena, kalitatean be bai segurrenik. Eredu planoaren kontsidero ustez bardinkor eta senidekorrek ez dauke beste oinarririk, jokua luzatzeak irabazteko probabilitatea gehitzen edo atzean gelditzeko arriskua eliminatzen dauelako suposizino enkubritua baino. Auzi honetan, bertsolarien eritxiari errespeto (edo bildur) handiegia dautsoenen zirkuito txikitik urten ezkero, bertsozaleen preferentzia, gehiengo nabarmenez, eredu aszendentearen aldekoa da. Formula diferenteak izan daitekez, baina, gitxieneko zentzun batez aplikaturik, edozein izango da azken lau finaletako irudi gregarioa baino interesgarriagoa. Bertsolarien

aldetik, aitatutako joera defentsibo eta norberekoiez harago, eredu batean nahiz bestean bardin-bardin justifika daitekez bakotxak lortutako postuaren poztasun, lankidetasun eta leitekezen tasun positibo guztiak. Final planoa bertsolaritzaren dinamika kontserbadorearen adibide garbia da.

Erabagi praktikorik garrantzitsuena batzorde antolatzailea hautatzea izan zen. Hiru lurraldeetako banakuntzaren izpiritura ahalik zuzenen egokitzen saiatuz, izen posibleen zerrenda luze bat osotu zen eta handik hautatu zen batzorde antolatzailea, zeinak aurrerantzean txapelketaren ardura guztia beragaz hartuko eban, beti be aurrez adostutako printzipio oinarrizkoen ganean. Teorian bertsolarien egitekoak hementxe amaitu behar eban: «Genezakeen batzorderik konpetenteena hautatu diagu. Orain ez diagu beste zereginik, trabatik kendu eta tokatzen zaigunean ahalik ondoen kantatzea baino». Idealki honela behar eban eta honelaxe erabagi zen, baina batzorde nagusian eta azpi-batzordeetan lan egin ebenek ondo gogoan izango dabe zelako mogidak eta presinoak izan ziren, batak hau, besteak hori, besteak ha. Nire aldetik, saiatu nintzen batzorde antolatzaileen bertsolariekiko independentzia osoa defendatzen eta, neure mogidei zegokenez, uste dot zorrotz mantendu nebala distantzia. Behin deskuidatu nintzen, oharkabean, batzar batera joaten, Zarauzko Ikastolan. Antolakuntzatik deitu eusten eta joan egin nintzen, batzarrak zer izaera eukiko eban ezjakinean. Txapelketaren azken txanpako girotze eta iruzkin orokorrak izango zirelakoan, ha ezustea hartu nebana, batzar guztiz ebazgarria zela konturatu nintzenean. Besteak beste, finalean zeintzuk lan izango ziren eztabaidan jardun genduen. Une batean hots egin neban:

—Baina zertarako hautatu genuen batzorde antolatzailea, auzi hauek bertsolarion artean tematzen hasteko?

Han gengozen, zaku berean, antolatzaileak (eragile, laguntzaile, gai jartzaile, epaile, aurkezle eta abar) eta bertsolariak (eliminatuak, eliminatzekoak eta finala jokatzekoak). Nire galderari ez jakon kontrako erantzunik etorri, baina inork ez zeukan sobra zegoen lekutik alde egiteko konturik. Funtzinoen nahasmen totala, influitzeko ahalbidea hurregi eukitzeak dakarrena. Batzorde antolatzailea ez zen bere autoritatea ezartzen ausartzen eta bertsolariek ez eben euren pisua sentiarazoteko aukerarik galtzen. Enboskada batean lez sentitu nintzen. Ez neban alde egiteko kemenik izan, baina azkenean antolatzaile bateri esan neutson:

—Egizue ahal duzuena ahal duzuen moduan, baina mesedez niri ez deitu gehiago honelako batzar intrigosetara.



## IA TXAPELKETA HANKAZ GORA

Euskal Herria, bertsolaritzari zegokonez, hiru lurraldetan banantzea eta epaimahaian hirurak hirunagaz ordezkaturik egoteko printzipioa hausteak 1989ko txapelketan gatazka gogorra ekarri eban. Artean Euskal Herriko Bertsolari Elkartea bere izate osoan antolaturik zegoen, baita herrialdeetako beste bertsolari elkarteak be, orain «Bertsozale Elkarteak» deituak. Bidezko zenez, Euskal Herriko Bertsozale Elkarteak hartu zuen larogeta bederatziko txapelketa antolatzeko ardura. Epaimahaia hornitzerakoan, ordea, hara Nafarroa-Iparraldeko lurraldetik ez ebezela izentatu eurei zegokezen hirurak. Hango elkarteak jarritako arrazoiak ziren Nafarroa-Iparraldean ezin zela hirukoterik osotu, ezin zela epaimahaian parte hartzeko prest zegoen eta gaitasun minimo bat zeukan jenterik aurkitu, eta horrelakoak. Arrazoi hareik ez dakit ahaleginik ezaren zurigarri ala beste arrazoi batzuren ezkutagarri izan ziren, zeren nork sinestu behar eban Nafarroa-Iparralde guztian ez zegozela epaimahairako moduko hiru gizakume?

Nafarroa-Iparraldeak bere ordezkariak aurkezteari uko edo gitxienez albo egin eutsonean, orduan hasi ziren epaimahia osotzeko tirabira luzeak, une batean txapelketa kolokan jarteraino.

pelketa barik txapel-harrapaketa dirudien honetan. Niregan jarritako konfidantza eskertzen dut, baina beste era batera gainditu beharko duzue berdinketa.

Ez naiz gogoratzen berdinketaren terminoez. Ez dakit proposamen bakarraren alde edo aurka zen, ala proposamen biren arteko aukera. Zena zela, azkenean adostasun tentso batek txapelketa salbatu eban. Bederatzi epaileak honela banandu ziren: lau bizkaitar, lau giputz eta bat (Itzaina) lapurtarra. Lehen inor ez zegoen eta orain bat behintzat aurkitu eben. Larogeta seiko 3-3-3tik 4-4-1era badago aldea. Kulturalki eta nazionalki, atzerakuntza tamalgarria nire ustez. 1989ko txapelketa nagusian beste tirabira txikiago batzuk be izan ziren, baina larriena epaimahaiarena izan zen duda barik.

Hurrengo txapelketak, 1993koa eta 1997koa, entzule gisan jarraitu nebazen gehiago. Honeitan ez zen, edo behintzat nik ez neban somatu, 89ko tentsinorik. Elkartea eginago eta sendoago zegoen eta apenas sortu zen ohiko zailtasun arruntez besterik. Ni neu ez nintzen prestakuntz prozesuaren barruan ibili, nahizta zenbait batzar orokorretan neure eritzi ezbardin batzuk jaulki txapelketaren egiturari buruz, batez be partaideen kopuruaz eta finalaren eredu piramidalaz. Entzule gisan, 1993koa askoz hobea irudítu jatan 1997koa baino. Egaña txapelduna sasoian ibili zen eta Euskitze txapeldunordeak aitatua izan den baino lan handiagoa egin eban. Nahizta askoren gogoan Egañak nabarmen irabazi ebalako inpresinoa gelditu, Euskitzeren lana txapeletik oso hur ikusi neban. Besteek be, lan irregularraren barruan, une eder asko biziazo euskuen. 1997koa nire ustez askoz apalagoa izan zen, txapeldunagandik beragandik hasita. Egun guztian zehar izan behar eben, noski, une distiratsuek, baina, oro har, 93an gozatu nebana, 97an sufritu egin neban.

1986ko txapelketara itzulita, argi daukat ez nebala irabazteko meriturik egin. Pare bat poto eginez ganera, nire kemena eta



ilusinoa ez ziren larogeikoak. Nire morala alde askotatik zulotuta zegoen. Horrek ez dau esan gura galtzeaz poztu nintzenik. Gau tristea pasatu neban eta hurrengo egunak be ez ziren samurrak izan, halako larritasun bola bat ok egin ezinik. Larritasuna astiro-astiro askatasun bihurtuz joango zela itxaroten neban eta halantxe gertatu zen, segurrenik derrigorrak eraginda, zeinak okerra abantailarantz transfiguratu ohi dauen, bizi-senak ez baitau uzten porrotaren sentsazinoa gehiegi luzatzen. Halantxe hasi nintzen gerta zeiten desiatua nebana sentitzen, hots, txapelaren zamarekiko arintasun bat, beharbada askatasuna esatea gehiegi litzatekeena, baina bertsolaritza askoz presino gitxiagoz biziazoten eustana. Orain ez nintzen txapeldun, ez neukan ezeri eutsi beharrik, ezer erakutsi beharrik, jenteak ikusi ninduen galtzen, askok segurrenik lehen baino maiteago izango ninduen eta, ez baninduen be, ez eustan hainbeste ardura, edo ez zidan hainbeste ardura. Liberaturik sentitzen nintzen. Nire barruko iratxo aluak sarri tentatuko ninduen, liberazino ha ala txapela aukeran jarririk, zein hartuko neukeen, eta autortu behar izaten neutson, ostantzean ez eustan baketan itziko-ta, segurrenik barriro be txapelari helduko neuskiola, baina, ha joana zen ezkero, goza daigun liberazinoaz, hau be benetakoa baitzen.

—Horixe komeni hiri!

—Komenentzia be galdu egin behar al da?

Denpora ez oso luzean, komenentzia edertasun bilakatu zen. Bertsolaritzari zegokonez, txapeldun nintzenean baino askoz hobeto bizi nintzen, batzutan pentsatzeraino: «Banidadiaittik ezpalitz, txapeldun ixetiek etxoan ezetako merezidu».

«Ni Trebiñotar» sortako 9-10. bertsoek dinoena gogoan gelditzeko modukoa izan zen. Finaleko kartzela gaia, hataz ardu-ratu zen taldeak ekarrita, eskuetan esposa parea jartea izango zen. Alegia, eskuak esposaturik, egoera haxe izango zen gaia. Halantxe onartu zen. Hurrengo bileran, —artean berba bat baino gehiago pasatua izango zen —, antolakuntz batzordeko batek aldarri

egin zuen: «Hori Amurizari txapela erregalatzea dek!». Bertsoak dinonez, «batek hots egin, bestek men egin», gaia aldatzea erabagi eben eta halan etorri zen «Udaletxeko bandoaren» gaia. Finaletik ez dakit zenbat denporara, Oiartzungo Madalensoron zortzi finalisten saioa izan zen eta han agertu zen zorioneko esposa parea, ez dakit bakar gaitzat ala zelan. Lopategi eta biok alkarren ondoan gengozen eta, kateak agertzean, murrikatu ginen: «Horra nun agertu den gure gai aborteue!».

## SOLDADU

1980ko txapelketara itzulita, nire bizitzan, gehiegi kostatu barik, hain bitxi eta ezusteko izango zen esperientzia bat egia ez gertatu izanaren pena bat geratu jatan betiko. Pena baino gehiago grina regresibo, beraz alperreko, gaizto bat, zeina, gertatu izan balitz, beharbada madarikatutzat jo izango neukeen. Neure lehenengo txapelaren jagitasun osoan nenbilela, gobernu militarrera aurkezteko deia jaso neban, ez dakit zer paperketa burutzera. Motiboa ahaztuta daukat, baina ez han entzuna. Paperei eragiten hasi ziren eta uniforme bat aldendu, beste bat agertu, halako baten aginte zerbait zeukala zirudien batek (militarren solapak danak bardinak begitantzen jataz, galaxia horretako izarrak ez baitodaz bereizten) esan eustan, gaztelaniaz noski, baina suposatzen da euskera badela militarren mezua adierazoteko gai. Esan eustan:

—Zuk ez dozu soldadutzarik egin.

—Nahiago neukeen egiteko lekuan egon banintz.

—Ba, egin beharra daukazu!

—Berrogei urtegaz soldadu joan behar al dot?

—Hemen soldadutzarik egin barik agertzen zara eta egin egin behar dozu.

—Eginbehar horrek ez al dau adinean eperik?

—Ez, motibo justifikaturik izan ez dauenaren kasuan.



—Parka, jauna, baina abadea nintzen eta eleizgizonak soldadutzatik libre zegozela entzuna neukan, hogeta hamar urteko kintadan kaperau militar joateko zozketa salbu. Pozik sartuko nintzen zozketa haretan, nengoen lekuan egon ez banintz.

—Non zengozen?

—Ez da berorren aurrean esateko duinegia, baina preso nengoen.

—Abade eta preso?

—Ez nintzen bakarra, jauna. Asko ginen.

—Abade jarraitzen al dozu?

—Ez, jauna.

—Orduan ez dago inongo arrazoirik, soldadutza egin ez dagizun.

Eta halantxe itzuli nintzen etxera, mataza kezkati bat eginik, soldadu joan beharko nebalako barriagaz. Inork ez eustan sinesten, baina egia zen. Hurrengo deialdian, abisua etor zeitenean, zakutoa hartu eta kanpamentura joan beharko neban. Orduan ondino intsumisinorik ez zegoen edo ez zeukan indar handirik. Egin beharreko kontsultak eginik, ez dakit gobernu militarrean bertan ala geroago, nire kasuan hiru hilabeteko kanpaina izango zen, bandera zin egin arte. Halan izatekotan, oso ezbehar interesgarria begitandu jatan. Soldadutza osoa izan balitz, ikaratuko nintzen, baina, hiru hilabetegaitik, abentura aberatsa izango zen eta nire txapelak be birbalioturik urtengo eban. Imajinatzen neban neure burua errepideetan atzera-aurrera auto-stop egiten, hamazortzi urteko mutiko kaskamotzakaz buru bat eginda, edo koartelean ofizial maniatiko baten zapata punta-okerrak garbitzen, edo soldadu beteranoen txarrikeriak pairatzen, («agureau atzeko erreflexuetan zelan dabillen aprobaeu beha'iuk»), edo Gamarrako klubetan (Arakan nengoela emonik) eskarmentubakoen aitabitxitza egiten, eta beti be lastaira baten ganean eta beste baten azpian, hataz eta bestetaz bertsoak jarten. Hiru hila-

betean egundoko sorta piloa onduko neban eta gero hareik herririk herri kantatzea hil arteko dibertsinoa izango zen. Ez dakit zer paper edo agiri aurkeztu behar nebala-ta, gobernu militarrera barriro joan nintzenean, ondino aluzinazino bat iruditzen jatan eta, kontua benetan aurrera zihoala jakinda, aurrekoan baino pozago, ia ilusinoz etxeratu nintzen. «Hiru hillebete zer dok, ba? Nire kurrikulum klerikal-presidiarijjoak hauxe bijjoan!». Denpora aurrera eta hatara mentalizaturik nengoenean, beste dei bat jaso neban, aurkeztu nintzen eta lehiatilan graduko militar batek jakinazo eustan:

—Ez dozu soldadu joan beharrik izango.

—Zelan? Zergaitik?

—Hemen bakarrik dino zugazko diligentziak anulaturik gelditzen direla.

—Hau marroa!

—Hau zer?

—Ez, ezebez. Ilusino handia egina baininntzen, aberriarentzat onuragarri izateko.

—Burlaizean ala?

—Ez, jauna! Grina nobatoen adina antxina joana dot, baina berorren jakinarazpenak nire bizitzako nobedaderik emonkorrenetako bat zapuztu dau.

—Ba, saia zaitez gehiegi ez nahibagetzen, frontera bialdu ez zagiezen.

—Joan al naiteke?

—Frontera?

—Ez, jauna. Etxera esan gura neban.

—Tori behin betiko lizentzi agiria.

—Eskerrik asko, jauna.

—Ez horregaitik. Hemen danok ari gara, bakotxa bere postutxoan, aberria zerbitzen.

Andragaiak lagundu eustan eta hau pozik zetorren bueltan, gorabehera haretaz larriturik ibili ondoren. Ez genduen jakin



nire betebehar patriotikoa zergaitik anulatu eben, baina kalkulatzen dot, izenari hobeto begiratuta, ez jakela zerbitzari lar fidagarria begitanduko. Neu be alde batetik nasaitu nintzen, nire kemenak ez baitauka abentura badaezpadakoentzat ezpalik, baina bestetik, eta oso itsatsirik, nire gogo amestian maitasun galdu baten nostalgia geratu zen.

## Bila eta atxilo

Geroago, larogeta zazpian, antzeko beste zerbait gertatu jatan. Bilboko polizian karneta barritzeko datuak itzi nebazen eta, ha jasotzera joan nintzenean, «itxaron apur baten» eta luzaro nindeuken zain. Txandan zegozenak, baita barriak eta hurrengoak be, pasatzen ari ziren eta ni geldi hantxe. Behar ebanik esplikatu ezinda-edo, goiza leihatilan erdi negarrez igaro eban baltz, argal eta luzera kakotuko bat be joana zen, nork jakin noranzko ezerezerantz. Leihatilako emakumeari nozean behin ekiten neutson eta itxaroteko erantzuten eustan.

—Zeozer gertatzen da ala? Eginda dagoen gauza bat jasoteko, honenbeste denpora behar al da?

—Itxaroteko esan dautsut. Besterik ezin dot egin.

Susmotxartzen hasia nintzen, izen-deiturakaz edo daturen bategaz edo auskalo zegaz alukeriaren bat gertatzen ete zen. Nozbait gizon ondino gazte samar batek barruko bulegoetatik urten eban eta hurbildurik esan eustan:

—Zu al zara Javier Cruz Amuriza?

—Bai, jauna.

—Erdu neugaz, mesedez.

Jarraitu neutson eta barruranzko martxa haxe ez jatan bape gustatu. Sartu nintzen, barruan beste gizon bat zegoen, mahaian

jesarrita, nire ekarleak atea itxi eban eta bulego erdian eta bi gizonen artean, zeineri begiratu garbi ez nenkiela, sail osoari orokorrean berbetan lez, esan neban:

—Egun on. Zeozer gertatzen al da?

—Atxilo zagoz! —hots egin eban ekarri ninduenak.

—Atxilo ni? Zelan? Zergaitik?

—Hemen «bila eta atxilo» agindu bat dago zure aurka.

—Bila? Non ezkutatu naz, ba?

«Atxilo zagoz» entzutea askoz gogorrago egin jatan «soldadu joan behar duzu» baino. Hau ezustea izan zen, bestea zartada. «Barriro hori danori paseu bi'jjoat?». Ekintz ahalbideren bat denik hutsalena bada be, neure esku ikusten badot, orduan bildurtia naz oso, arriskuaren arabera, baina halanbeharrak erabat atzematen nauenean, inoranzko eskapu barik, orduan nire erreakzinoa neure buruari bertan behera iztea izaten da. Ez dautsot izten, bera joaten jat, larritzeko be helduleku barik. Geroago gogoa hasiko da barriro ahalbide barriak hautematen, edo asmatzen, zuloan be beti baitago mogida txikien aukera, destinoaren haripunta batzuk norberagan dagozela pentsatzeko moduan, eta orduan barriro hasten naz ikaratzen. «Atxilo zagoz». Bat-bateko zartadaren uhinak hedatzen diren heinean, senti daiket lasaitasun inbertitu bat, galdera filosofiko batzuk egiteko. «Zelan? Zergaitik?». Burua ez da, ostera, abandonu orokorrera mentzen eta pentsakizun zirkunstantzialetan lerratzen da, egoeraren bueltarik eza distraitzeko bada be. «Zelan gogoratu leijjok gixonari holako lekure bakarrik etortie? Oin nok jakin bi'jjok ni nun naoen eta zetan naoen?». Egoeraren arrazoi bat badogu. Urtenbiderik ez badago, euki daigun esplikazino baten gaintasuna. Edo erru batena, bardin da. Errua norberea izateak galmenari zeozer pertsonala aportatzeko abantaila dauka, bere baitan justifikatzen baita. «Besterik ez heuan merezidu». Beraz, tokatzen zen lekuan gagoz eta ez dago errua zuzentzeaz arduratu beharrik, apelatuak (norbere buruak) ezin



baitautsu ezertan lagundu. Ahalbide bakarra bere aurka amorratzea da, baina gitxieneko bihozberatasunak agintzen dau ezin dela indefentsino totalean dagoen bategaz abusatu. Ezer egiterik ez badago, balia daigun ezer egin beharrik ezaren segurtasuna.

—Aizue, jaunak! Parka, baina, ordena publikoaren zerbitzari zuhur gisan, (honei euren eginkizunaren autormenez berba egin behar jake), nahitaez ulertu behar dozue egoera honen okerra. Ezertatik ezkutatu beharrik izan baneu, uste al dozue honen xalo etorriko nintzela nora eta poliziara, neu bakar-bakarrik?

—Hemen agindu hauxe dago eta guk ezin dogu, zerbitzari zeuk dinozunez zuhur gisan, albo egin.

—Baina hara, jaunak! —Nire bertan-beheratasuna dardaratuz zihoan, gertaeren araberako berbak ezin josiz. Lanik etsigarriena ebidentzia argitu beharra gertatzen jat, berbak beti geratzen baitira frogatu nahi dena baino askoz atzerago. Poliziak benetan hotz eta latz ikusten nituen —. Noztik dator agindu hori? Ni pertsonaia publikoa naz. Ez dakit zuek bertsolaria zer den jakingo dozuen, baina herririk herri, programa agirietan, jente aurrean nabil eten barik, gura dauenak nahinoz eta nahinon atxilotzeko moduan. Frantziako muga be (gorde dagidan «Iparraldea» beste baterako) maiz hara-honatu izan dot neure eginkizun kantarian, zuen lankideen eskuetatik. Zelan atxilotu behar nozue orain, neu zuekana otzan-otzan etorri nazela? Paper horreitan okerren bat egon behar dau nahitaez.

—Okerra bada, guk ezin dautsugu joaten itzi, argitu arte.

—Deitu egizue nonora eta bilaizuez argitasunak.

—Madrilgo hain auzitegiko (ez dakit zein esan eben) fitxategira deitu behar da eta ordu honetan han ez dago inor.

—Etorriko naz, argitzen dozuenean.

—Ez zara etorriko. Zu atxilo zagoz!

Polizia peto lez eta atxilo peto bateri lez mintzo ziren, txakurtasun profesionalez. Nik neure esturaren barruan, (hemetik

komisaldegire joan bi'jjoat, iñok nun naoen ez dakijjela? Ze motibo ixen leikek? «Lehenago ere emondakoak danak hartu dira». Atzera hori?) zeozer egin zegiela ekiten neutsen, gitxienez ahalegin bat egin barik ezin ebela itzi. Nozbait batek telefonoari heldu eutson. Dei bat hara, beste bat harago, bitartean neure errepasoak egiten niharduen, zer izan ete zitekeen, zeren aurrez prebenitu behar nintzen, eta ez neban lorratz garbirik aurkitzen. Bai, ostera, gogoratu nintzen zelan, argumentutzat jaulki barri neban mugako iragaitzan, batzutan nabarmenki luzaro egonazo eusten, ez dakit zelako aberiguazinoak eginez, azkenean beti «segi daikezu» agindu arte. Alde batetik trankiltzen ninduen gauza larria ezin izan zeitekeelako pentsamentuak, bestela ez baitziren luzamenetan ibiliko, baina arrazoi sendo horrek inspiratzen eban lasaitasuna atoan apurtzen zen ezezagutzaren aztoramenean.

Nozbait Madrilgo auzitegiko andereño idazkari batek aurkitu bide eban paperen bat, epailearen agindu jatorrizkoa, antza, non agertzen zen nigazko «bila eta atxilo» delakoa preskribaturik zegoela. Fffff!! Paparraren zabalkerak burua gorantz jaurti eustan eta gorantz putz egin neban, ez hango ezer amatatzeko, surrarentzat espazio liberatuen bila baino. Kostata sartzen zen arnasak sustoa desteinkatu eban, baina ez eban piztia bere zulotik ataraterik lortu. Bihotzak kontrol barik talkatzen ninduen eta ez dakit noraino desbokatuko zen, agindu ez baneutso: «To! Astokeririk ez oin, eh!». Polizi parea ahal neban kortesiarik sentibageenez agurturik, lehiatilako emakumearen eskutik karnet barria jaso eta kalea zapaldu nebanean, ez nintzen ez gizon barria, ez mundu barrian, baina autoa hartu eta etxera joan neintekeen. Mundu berbera zen, hiru ordutan erdi alienotzat neukan egoitzara jatsiazo ninduena, kontatzen hastearenik be ez zeukana, gerta zeitekeen pasadizorik benignoenetakoa. Urte batzuk lehenago larritasunaren burduntzian zeozeri heldu behar eta nire izena kantatzea gogoratu jakon errukarriak kondaira lazgarriagorik eukiko dau. Ez uste, halan be, pentsakizun konparatiboak inpaktua txikitu



ebanik, areagotu baino, eta ondino be hortxe dirau, deskantsuan nahi badozu, baina arnasa hartzen dauela igarteko moduan.

## ARABA-BIZKAIKO TXAPELKETA 1987

Bizkaiko txapelketa bakarrera aurkeztu izan naz neure bizitzan, hain zuzen 1987kora. Finala Arriagan jokatu zen urte horretako abenduaren hogeian. Lopategi izan zen txapeldun eta nik bigarren egin neban. Aurreko azken Bizkaiko txapelketa 1966an jokatu zen, beraz, hogeta bat urteko etena haustera zetorren oraingo hau eta, nire bertsolaritzan egokitzen zen lehenengoa izanik, ez neban dudarik izan aurkezteko. Hurrengorako, artean Euskal Herriko txapelketa nagusira eztarriko arazoakaitik huts egina nintzela, txapelketatik erretiratzeko erabagia hartua neukan eta ez neban Bizkairako be izenik emon.

Txapelketa honetatik gauza bi geratu jataz gogoan. Lehenengoa, harritu eta mindu ninduena, zelan batek baino gehiagok txartzat hartu eban nik bizkaieraz egitea. «Zertan hasi duk orain Amuritza bizkaierara bueltatu guran?». Erreakzino honeri guztiz okerra neritxon orduan eta askoz okerrago deritxot gaur. Ez nintzen inora bueltatzen, Bizkaian beti egin izan baitot bizkaieraz hiztun herritarren aurrean eta horretan ez dot sekula zalantzarik euki. Beste kontu bat da euskaldun barriei edo honeik asko direla suposatzen den plazetan zelan egin behar den. Horretan behin baino gehiagotan euki dodaz zalantzak, Bilbon, esaterako. Askotan batuan egin izan dot, baina gaur egun han be aukerarik gehienetan bizkaieraz kantatzen dot. Beste leku batzutan, Ezkerraldeko herrietan eta antzekoetan, inoz antolatzaileei itaundu izan dautset zelan gura eben, baina Bizkaian gertatzen diren dudazko plaza ugari samarrak albora itzita, herri euskaldunari sekula ez dautsot batuan egin. Bermeo, Markina, Gernika, Zornotza, Mungia, Urduliz, Orozko, Zeanuri, Berriz... horko bertsozaleek ez eben nire

ahoan baturik sekula entzungo, deskuidoren batzuz harago.

Euskalkiaren Gipuzkoako partean be halantxe hasi nintzen, baina ikusten neban jenteak ez ebala begi onez hartzen. «Hik geure moruan eitxen dok» abertitzen eusten tonu gitxieskorrez, «norbere moduan» egitea kategoria apalagoa bailitzan. Orduan ahalegintzen nintzen euren euskalkiaren izateaz ohartuazoten, zelan administratiboki Gipuzkoa izan arren, hizkuntzaz beste eremu bat osotzen eben eta abar, baina esplikazino larregi emon behar zen, azkenean inor ez konbentzitzeko. Bere euskalkiagazko harrotasun minimo bat ez daukanari gatxa da argumentu afektiboak emotea eta nekatu egin nintzen atxikimendu positiborik lortzen ez eben azalpenak errepikatzen. Bizkaian be euskalkiari buruzko estimu urri bardintsua zegoen, baina erreparorik jarten ebanari (hemen be gipuzkera prestigiatuago zegoen bizkaiera baino) nahikoa zen «Bizkaian ezkaoz ala?» argudiatzea, bertako bertsozaleak atzera egiteko. «Ah, bai, bai! Hori bai gero!». Ad hominem argumentu honek ez dauka beharbada zentzun linguistiko handirik, baina guztiz eraginkor gertatzen zen. Gipuzkoan, ostera, ezin dozu Bizkaian egotearen argumenturik erabili eta azkenean erabagi neban: «Hor konpon zeuen konplexuakaz! Gipuzkeraz entzun gure bozue, halantxe kanteuko jjoat eta kittu».

Bizkaiko txapelketan ez neban duda izpirik izan bizkaieraz egiteko. Bertsolaritza bete-betean ahozko hizkuntz eremuan sartzen bada, non egin behar dogu bizkaieraz, Bizkaian ez bada? Bertsolaritzaz harago be, bizkaitarrok nahikoa astakeria nabarmena egin dogu, geure burua batuari itsuan entregatuz eta euskalkia sasira jaurtiz. Objetiboki hizkuntz astakeria neurribakoa izanik, subjektiboki ez da gehienean maleziagaitik izan, kokolotasunagaitik baino. Uste izan dogu euskera standarra maila guztietan aplikatzekoa zela, ahozkoa txikitzeraino, eta batez be uste izan dogu euskaldun guztiek horixe egingo ebela eta azkenean konturatu gara Mendebaldeko euskalkikook garela hori egiten dogun bakarrak, Euskal Herri erdia baino gehiago bere ganean bizi den euskalkia izanik gurea. Batzutan emoten dau euskera batua bizkaitarrek bakarrik egiteko sortu zela, edo, argiago esanda, bizkaitarrek bizkaieraz egin ez zegien.



Mendebaldeko euskalkiak, restriktiboki bizkaiera deitzen jakonak, Bizkaia osoa, Gipuzkoaren zati handi bat (ia Deba Arro guztia, hasi mugako Mendaro-Elgoibartik eta Eibar, Soraluze, Bergara, Antzuola, Arrasate, Elgeta, Oñati, Aretxabaleta eta Eskoriatzan zehar Leintzeraino) eta Araba osoa (gaur geratzen dena eta lehenago izan zen guztia) hartzen dauz. Ia euskaldunik erdiak eremu honetakoak dira eta, biztanleei begiratzen badautsegu, milioi eta erditik gora hortxe bizi gara. Euskal Herriak 2.846.976 biztanle daukazela jorik, (Elhuyar Hiztegi Entziklopedikoak dakarrena), euskal herritar erdiak baino dezente gehiago mendebaldeko euskalkiaren lurrean bizi gara. Zelan egin behar dogu euskera batu on eta onargarri bat, Euskal Herririk erdia zabortegira botata? Eta non garatu behar dau euskalkiak, bertsolaritza lako komunikaera ahozko eta zuzenekoan, ia pertsonalean, ez bada? Zorionez egoera tamalgarri honeri buelta emoten hasita gagoz, bai hizkuntza orokorrean, baita bertsolaritzan be. Araba-Bizkaiko txapelketako finalean ia inork bizkaieraz ez egitetik orain ia danak bizkaieraz egiterantz aldatuz doaz. Hori atzerakuntza dela uste dauenak hizkuntz erizpideak zientzia sanoagotik barritzea pentsatu beharko dau.

Txapelketa haretatik bada beste kontu aitagarri bat. EGIN egunkariko bihamoneko kronikaren titularrak, adibidez, zinoan: «Karpov eta Kasparov balira bezala aritu ziren Lopategi eta Amuriza». Laudorio gizen samarra iruditu jatan, baina gauza ona ez da inoz mingarri, guzurra izanda be. Bertsozaleakan horren antzeko sentsazinoa geratu ei zen. Poztekoa da eta lausengura beti gagoz sineskor, baina ez zen hainbesterako izan.

Gero puntuaketa ikustean, konturatu nintzen epaimahaiak ez ebala inondik be inpresino parekatu ha jaso. Lehenengotik bigarrenera 52 punturen aldea emon eben, hamabost bertso eta

sei epailegaz. Aurreko urteko Euskal Herriko finalean hogeta seina bertso eta bederatzi epaile izan ziren. Bizkaiko puntuake ta proportzino haretara ekarririk, 135,2 puntuko aldeak urteten dau:15 X 6 = 90. 26 X 9 = 234. Beraz: 90egaz 52ko aldea bada, 234gaz 135,2 urtengo leuke. 234 X 52: 90 = 135,2. Euskal Herriko txapelketaren proportzinoan, Bizkaikoan lehenengotik bigarrenera 135,2 punturen aldea izan zen. Diferentzia horregaz Karpov-Kasparov konparazinoak adierazoten dauen «lehia estua» barik «jipoi nabarmena» titulatu beharko zen.

Aitatu Euskal Herriko finalean, Lizaso txapeldunagandik bigarrenera 17,5 puntu egon ziren; hirugarrenera 21; laugarrenera 32. 1989koan Lopategi txapeldunagandik bigarrenera 35,5; hirugarrenera 41,5; laugarrenera 73.

Araba-Bizkaikoan eta txapelketa nagusiko

Proportzinoan, lehenengotik bigarrenera 135,2 puntu

Xake-jokoa aitatu da, baina zenbakiok emoten daben besteko hurbilkuntza dadoak botata be etara zeitekeen.

## ISILALDIA

Larogeta zortziko Gabon aurretxoan gogoan daukat azken saioa Arrasaten egin nebala. Nire buruan haxe neukan gai jarridun azken saiotzat, baina bestela be halan beharko eban, eztarria txarto baineukan. Saio aurretik eta egunean zehar kafesne beroak-eta hartzen ibilten nintzen, zeozer bigunduko zelakoan, eta geroago jakin neban eztarri minduarentzat hotza nahiz beroa, biak direla txarrak. Karrask eta karrask aritzen nintzen, trabaren bat libratu guran, eta gero jakin neban horixe zela okerrena, minduta dagoena urratu besterik ez ei da egiten-da. Arrasateko saioa benetan minduta amaitu neban, baina pozik azkena zela-ta, ganera gabonak gainean. Urte barrian joango nintzen otorrinoagana,(izen osoa emoten ez naz atrebitzen), beraz, gabonetan, hotz zein bero, parera



zetorren guztia sartzen neban, hor konpon pentsatuz, azkenaren sentsazino guztiek emoten daben desneurri asegatxean. Erregen hurrengo astean espezialista bategana banoa eta dinost:

—Buff! Korda honeik azenarioak dirudie. Inflamazino brutala daukazu.

—Zerena?

—Inflamazinoa jatsi arte ez dago garbi jakiterik.

—Orduan?

—Isiltasun totala gorde behar dozu, hau desinflamatuko bada.

—Totalak zer esan gura dau?

—Totala! Xuxurlarik be ez!

—Baina etxean eta...

—Ez etxean ez amesetan. Hamabost bat egunean ez dozu ahorik edegi behar eta orduantxe ikusiko dogu zelako eboluzinoa daroan.

—Mutu orduan?

—Esan dautsut ahorik ez dozula edegi behar, jateko eta edateko ezinbestekoa baino. Idazten badakizu, ezta?

—Idazlea naz.

—Ba, hartu blok txiki bat aldean eta, ezer behar dozunean, praktikatu zeure dohaia.

Ez hain antxina, hitza joatea abadeari azken ordura deitzeko motiboa izaten zen eta hara non nengoen osasun ederrez eta berba barik. Etxean batzutan egoera barregarriak gertatzen ziren, gauza elementalez harago gatxa baita keinuakaz ezer adierazotea. Zer materialak eta banan —«ekazu ogia, koilare bat, liburu bat» eta horrelakoak— nahikoa errez adierazoten dira, baina zelanbaiteko prozesu mentala suposatzen ebenetan ez neban lortzen andrea desesperatzea besterik. Prozesu mentala esatean, ez nabil ideia konplexuez. Liburu bat, orokorrean, ondo adierazo arren, normalean ez da edozein liburu izaten eta orduan zelan

esplikatu behar dozu, besteak ulertzeko moduan, norbere ondo-usteak ez baitau ezetako balio, adibidez, Joxe Azurmendiren «Espainolak eta Euskaldunak» gura dozula? Boligrafoari heldu beharra zegoen eta honelako mezu laburretan ez zen lan handia, baina alkarrizketa minimo bat haritzeko, papera etsigarria da, bai norberetzat, bai solaskidearentzat. Oinarrizko premia naturalek —«gose naz, egarri naz, min dot, logura naz, alde paretik, hurbil zaitez»...— euren keinu naturala dauke, baina hortik aurrera mundua itxi egiten da. Badakit keinu hizkuntza oso garaturik dagoela, baina hizkuntza bat da, ikasi beharrekoa, eta, ikasita be, danak ez dira hizlari bardin trebeak izango.

Harrezkero askotan pentsatu dot zer ete litzatekeen okerrago, hitza ala ikusmena galtzea, eta, derrigorrak jo ezkero, ez dakit zein hautatuko neukeen. Etxean hainbestean pasatzen ginen, baina kaminora pasiatzera urteten baneban, edonogaz topo egin neikeen. Hau normal hasten zen berbetan eta, nire mutu plantak ikusita, ikaratu egiten zen, auskalo zer pentsaturik, baina nik ezin neutson esplikatu ez zela gauza ikaragarria, desinflamazino aro soil batean nengoela baino, eta badaezpada hoba neban eztarria keinu gehiegiz ez seinalatzea, okerrena pentsa ez zegien. Une biolentoak izaten ziren, alkarren bildur diren mundu bi lez, ez berez unibertso etsaietakoak direlako, alkarren aurkigunerik izentatu ezin dabelako baino. Bisitak be, eskergarri izan arren, gogor samar egiten jatazen. Nahizta hareik jakin eta ulertu ez nebala berbarik egin behar, norberari egiten jako arrotz arpegi irribarretsuen, karinosoen, espresino guztietakoen, eta ganera hiztunen, ikus-entzule soil izatea. Pantailan lor daitekeen lez, bigira bateko keinu eta mogimentuei abotsa kentzeak hilaritatea eragiten badau, norbere berbarik ezak kontestua muntros bilakatzen dau, bizkundea iruntzietara lez. Minutu batzutan eusten dautsozuna luzatzen ari bada, hiltze probisional bat desiatzen hasten zara.

Hirulau astetara medikuagana itzuli nintzenean, gitxieneko berba batzuk egiteko baimena eman eustan, beti be ahalik leunen, ezelako indarrik egin barik. Hiru bat hilabete egin neban inflamazinoa jasten eta orduan agertu zen gatxa. Ez ziren urte batzuk lehenago operatu eustazen moduko polipoak edo itsaskin esternoak, kistea baino, zeinak korda barrutik lesionatzen dauen eta ebakuntza askoz delikatuagoa dakarren. Egitekoa egin genduen eta ebatondoan ere isilune totala ezarri eustan, gitxienez hilabetean. Gero, berbetan polito-polito hasteko agindu eustanean, ez zetorren hotsik, ez ozenik ez muturik. Normala zela ulertzen saiatu arren, batzutan benetan ikaratzen nintzen, egunak aurrera eta eztarrian hilobi baten miniatura sentitzean. Hitzari mehatxu kategorikoak bidaltzen neutsozen, itzultzen ez bazen, subjektu barik itziko nebala eta abar, nahizta hori gertatzera, bera be sobra zegokeen.



Gatxak ez dira bakarzale eta ebatondoko isilaldiak ez ninduen libratu orkatilako istripu batetik. Danak dira kasuak eta ha be bat gehiago, batez be norberea denean.

Gizaburuagako Erreka baserrian gengozen, andrearen etxean, domeka gehienetan lez. Auzoko ume bat sarri eroaten genduen geugaz. Ondino oso txikia zen, urte birik ez behintzat, urari «aba» eta holako berba batzuk bakarrik esaten baitzekien. Nonbait «ura» baino «agua» errezago egiten jakon ahozkatzen eta han joan nintzen, ibai ondoan gorantz, presa handi bateraino, umea besoetan hartuta, «aba, aba, aba» eten barik zinoala. Haren irrika ura ikustea, ikutzea, bertan sartzea zen eta horrexegaitik neroan, haren txundiduraz neuk gozatzeko. Presak alde batean landa garbia eta zelaia dauka eta aldasgune batetik bertara jastean, hanka batek laban egin eustan eta, besoetako umea babesteagaitik, jauskera txar bat izan neban. Krik-krak entzun neban eskumako orkatilan. «Ointxe ixorreu nok!» neure buruari eta «geldi, Idoia!» esaten neutson, jausitako lekuan jesarrita, besotik gogor helduta, aba-abaka uretarantz tiratzen eban umeari. Mareatzen ari nintzen. «Ez! Mesedez», erregutu neutsen, izuturik, umea metro batzuk haragoko presarantz txaka-txaka imajinatzen nebala, fede okasi-

nozkora itzultzea gehiegizko utilitarismotzat joko neukeen Jainkoaren hurrengo ahalguztiei. Sinesten ez dodan nonork laguntzen badaust, bere arazoa da. «Ama Lur! Ama bazara, ez eidazu azpitik lurrik ken, ume hau baten batek hartu arte. Geldi, Idoia! Abak erre eitten deu. Pu! Erre!». Ahotsa doi-doi neukan eta ez nenkien entzuten eban be, presako uraren hots bortitzean. Eztarri sanoz be alperrik zen helka hastea ibai kontran atzez ikusten neban etxerantz edo ibaiaz beste aldean eta sastraka artetik, berrogeta hamar bat metro gorago, unadak bakarrik eta autoak ziztuan pasatzen ikusten ziren errepiderantz.

Etzun egin nintzen, salbamen bakarra lasaitasuna izan zeitekeela pentsaturik, askatu guran zebilen umearen besoa errukibarik estutuz. Une batez, berez luzea izango ez zen, baina betiko luzatu zen une batez, konortea bazihoala erremedio barik sinestu neban, ibai ondoko arbolak eta mendi hurbilak biraka ikusten bainebazen zeruko hutsunearen tripapean. Begirik ez neban itxi gura, baina euskarri bako biraketa larri harek menperatu behar ninduela sinesturik, begiak itxi nebazen, dan-dana ixten saiatu nintzen, umearen besoa izan ezik, ea lortzen neban konorteak inondik eskapurik ez izatea. Betiko luzatu ez balitz, berez oso laburra izango zen une batez, sentitzeko gauza nintzen larritasunik tragikoena bildu zen nire baitan eta beharbada intentsitate kontziente horrexek —senera naitenean, umea urak eroan dauela aurkitzen badot, nork maitarazo behar daust bizia?— salbatu eban nire argitasuna. Apurka-apurka euskarri bako biraketa aldiberean iheslari eta inguratzailea geldotzen hasi zen, ur bizitik geldira heldu den koltxoneta ganean lez oso bira lasaian sentitu nintzen arte. Azkenean lortu neban azpiko lur geldiaz berjabetzea eta begiak zabaltzen ausartu nintzen.

—Idoia! Hemen zaoz?

—Aba! Aba!

—Bai, pitxin! Ointxe joango gara. Pupu ein ddot! Zuk eztekozu iñun pupurik?



—Aba! aba!

—Oh! Ni baño hobeto zaoz orduen. Ia! Lagundu hankatxu hau mogiduten.

—Aba! Aba!

—Aba ez! Hankatxue!

Bazkaria mahaian zela abiatu ginen eta baten bat deika ager zeiten itxaron neban, alperrik, eta zelan edo halan presa ondotik urrundu egin behar neban, ondino tragediaren mehatxuak inguru guztia dominatzen eban-da. Kontuz-kontuz zutuntzen hasi nintzen, ez hanka ezbehartuagaitik, (hankamotzak be ez al dira ibilten?), mareatzeko bildurragaitik baino. Tente, apur bat hanka sanorantz makur, umearen besoari jarein nahi ezta, astiro-astiro ibilten hasi ginenean, hankan ez neban aparteko minik sentitzen, lurrean polito pausatzen zen eta beharbada kolpe gogor samar bat besterik ez zela izan pentsatzeak animatu egin ninduen. «Goazen, pitxin! Ezaitut lepoan eroango, ezta? Ostantzien barriro jeusiko gara. Holantxe txaka-txaka. Bazkari gozoa janda etorriko gara aba-aba ikusten». Iritsi ginenerako bazkaltzen hasiak ziren:

—Baiña nun zabize zuek?

—Hankan aberijje ein ddotela uste dot.

—Zer ein ddozue?

—Ezteko ezer larrijjen antzik, baia jeusi ein gara.

—Umie be bai?

—Bijjok! Besoetan neroiela laban eindde, baia honeri etxako ezer paseu. Orkatillie trokatu jjatela pentset'ot.

Bazkal ostean badaezpada Galdakaora abiatu ginen eta han uste baino oker handiagoa agertu zen. Orkatila toki bitatik apurtuta. Baneukan errezeloa kraskada bi hareik ez zirela bestebakoak izan. Hanka igeltsatu eta prozesu luzea abiatu zen, igeltsuan lehenengo eta gero makuluakaz luzaro, rehabilitazino mantso eta gogaikarrian. Aldi berean, foniatragaz eta gimnasioan, ezta-

rria eta ibilpidea lantzen, lehengoez ganera sei bat hilabete erdi tatarrez emon nebazen. Hankagaitik ez izatera, isilaldia atsedenaldi edertzat eta lan eta gogoetaldi oparotzat aurreikusi nebana, bizimodu arrastatua egokitu zen, bai neuretzat, bai andrearentzat, giza-tramankulu puskatu baten garraio etenbakoan. Zorionez bietatik ondo errekuperatu nintzen eta, batera izatean, banan galduazoko eben denpora aurreztu nebala pentsatzea kontsolapen ahaleginkor bat baino gehiago izan zen.

Bolada hatantxe izan zen beste toki batean kontatzen dodan Anje Duhaldegazko planaren abiagunea. Bertso sorta mordo bategaz zeozer egiteko pentsakizuna nerabilen eta, eztarriko ezbeharra bide zela, noz arte luzatuko zen eta zelan osatuko nintzen ez baitzegoen bape argi, kantari bateri proposatzea otu jatan eta Anje Duhalde hautatu neban. Beragaz solasaldi bat egin nahi nebala eta hitzordua Donostia ganeko Aritzeta restopean jarririk, emazteak eroan ninduen, makuludun bainenbilen, eta alkarrizketarako be baneban bitarteko baten premina. Alkar ulertze lantsua izan bazen be, proposamena azaldu ahal izan geuntson berak onartzeko bestean, errukiz beharbada, nahikoa ikaraturik geratu baitzen gizonaren halako hondakin itxuraz. Bueltan pozik itzuli nintzen, oso asmo desiratu bat bideraturik itzi nebalako. Badot dohai bat, hasian egina eta eginean urregorria ikusteko, eta, antizipazino horreik gero sarritan zaputz edo oso motz geratu arren, aurrez gozatutako ilusinorik inork ez daust kenduko. Egun haretan Anje Duhaldegaz halako epe baterako berbatu nebanari be kostatu jakon abiatzen, baina azkenean gauzatu zen.

## Barriro plazan

Ia urte eta erdiko erretiraren ondoren, 1990.eko maiatzean berplazaratu nintzen Berrizen, neu bizi nazen Andikoa auzoko Asentzio jaietan, Lopategi lagun nebala. Barriro hastea lakoa izan zen



niretzat, hain arduraz batetik eta hain ilusinoz bestetik. Arduraz, ze ez nenkien zelan aurkituko nintzen kemenez eta ahalmenez eta bertso munduak zelan hartuko ninduen. Izan be, gai jartzailedun saioetan ez parte hartzeko erabagia nekarren eta saio horreixek ziren, hori banenkien, bertsolaritzaren plazarik prestigiosenak, bai bertsozaleentzat, bai entzuleentzat, bai batez be komunikabideentzat. Beraz, nire jarrera bertsolaritzagazko plantotzat edo desplantetzat har zeitekeen eta neurri handi bateraino bazen izan be. Nekatuta nengoen, ia erreta be bai, txarto planteatutako saioakaz eta bertsolarien marmarrakaz alde batetik (hau gaizki, hori oker, bestea desegoki) eta bestetik pasibitate gregario haregaz.

Gazteak bazetozen, iritsiak ziren, elitea aldatua zen, baina dinamikan ez neban aldakuntzarik somatzen. Urteak neroazen salatzen errua ez zela gai jartzaileena, bertsolariena baino, gai jartzaileek zekiena eta ahal ebena egiten ebela, bertsolariak zirela inork ezarritako eta sarritan eurek kritikatutako eskemari ezer aportatzeko borondaterik (edo ahalmenik?) ez zeukenak. Emondako gidoiari ahalik ondoen erantzun (edo «jasan» beharbada) eta etxera. Ordaindu badautsue pozik eta ostantzean herrigintzan ari garela eta konforme. Hurrengoan auskalo beste zein gidoiren mende eta horrelaxe sekulun sekula, sarritan biktima lez ganera, halako baldintza txarrak, halako gai ganorabakoak, halako aurkezle txoriburua, edo hiztun kamutsa, edo gizajo urduria tokatu jakelako. Maiseoa eta marmarra ugari, oso umore puntuan gura badozu, inogaz hasarratu barik, harmoniarik estoikoenean, baina ezeri eragiteko ganora barik. Azken batez konformismorik erosoenean. Dana inoren esku izteak, norbere ekimenenetik libratuz ganera, kexatzeko aukera emoten dau, gauzek ondoegi urten ez dabenean. Beharbada pasibitatearen adikzinoa ez dator hainbeste erosotasun grinatik, errua inori egozteko preminatik baino. Alde horretatik gai jartzaileak bertsolariakan funtzino redentorea egiten dau.

Gaiak jarritako saioen ardura eta ernegu alperrekoei agur eginda, bertsoketa librera berplazaratu nintzenean, nire bat-bate-

ko bertsolaritzako arorik gozatsuena abiatu zen. Kanporantz ez zen beharbada distiratsuena izango, segurrenik ibilera marjinala izan da, ez dau ezelako eraginik ez jarraipenik euki, jabeari setoso fama ekarteaz besterik, baina neuretzat egunsentiko freskurara edegitako leihoa izan da, zeina baga segurrenik nire bertsolari bizitza bat-batekoak fortunatik baino gehiago eukiko eban porrotetik. Pena bakarra da leiho horretara ia berrogeta hamar urtegaz jagi izana. Saio horreitan gehienak plaza libreak eta bertso afariak ziren, gehienean bertsolaritzaren dialektika oinarrizkoa eta onena osotzen dauen bikotean. Bi bakarrik eta gai jartzaile barik izanik, erantzukizuna, banaketa matematiko soilez, handitu egiten da, baina baita satisfazinoa be, itxurazko lana izan bada. Dana norberak egiten dau, bai bertso, bai gidoi. Ibilbidea bera da inprobisazinoaren erronkarik eta objekturik ederrenetako bat. Gaidun saioan lan hori aurkezleak egiten dau, bidea eta norabidea berak ezarten ditu, bertsolaria agindutako tramu bakotxa ahalik ondoen korritzera mugatzen da. Plaza librean norberak begiratzen, obserbatzen eta bideratzen dau dana eta abentura inprebisible baten aurrean zagoz beti, zegaitik edo hagaitik interesgarri, ezusteko, hunkigarri edo danak batera izan bada, amaieran norbera gehien txundiazoten dauena. Ibilbidea norberak egin arren, aurrez ez dakizu zelakoa izango den. Aldez geroztik bakarrik dakizu nondik nora ibili zaren. Honelako saio ondo doan baten bideko gozamena eta ondorengo poza dira niri bat-bateko bertsogintzak emon daustazen bibentziarik ederrenak.

Efektu hau bertso afarietan edo bazkarietan areagotu egiten da. Aurretik jatordua izanik, badago astia tokian kokatzeko, inguruaz jabetzeko, lagunartean barneratzeko, baita norbere gogoa animetako be. Entzuleen arreta gehienean handia izaten da eta kantatu be plazako saio batean baino gehiago egin behar izaten da. Horrek probabilitate gehiago emoten dau, une batean ez bada bestean, saioari distira emoteko. Lehenengo saioa zeozergaitik patal samar joan bada, atseden baten ondoren beste aire bat emon daitekio eta azkenerako goiera handietan planeatzen aurkitu, garaipen totalaren sentsazinoa itzirik. Lehenengo saioak ona urten badau, bigarrenerako lasaiago zagoz eta lasaitasun horrek hobetzeko aldartea eskeintzen dau. Txarto hastetik onera zuzentzeko parada baldin badago, ondo hasteak hobera jotea dakar gehienean. Bertso afaria izango da, bertsolaritzaren orokortasun kontserbadorearen barruan, jeneroak emon dauen inbenturik onenetakoa, bertsolariarentzat baldintzarik oparoenak eskeintzen dituena.



Lehenago be baziren, eta badira, bazkariak eta afariak, alkarte eta abarretan, baina oso diferentea zen. Alkarte gastronomiko batean, esaterako, batzen diren guztiak ez dira bertsozale edo bardin bertsozale. Sarritan erdaldunak be badagoz tartean. Okasino honein helburu nagusia beste bat izan ohi da, urteko bazkaria, jaietako ohitura, edo otordu eder bat beste barik, non bertsolaria edergarri lez doan, ez motibo nagusi gisan. Orduan, tokien arabera, nahiko entzuleria ezbardina batzen da. Batzutan gerta daiteke danak euskaldun eta bertsozale izatea, baina beste askotan, nahizta oso herri euskalduna izan, bertsoagazko interes ezbardineko jentea alkartuko da. Eta gehienean oso bazkari edo afari ona izanik, edaria barra-barra eta onetik ibiliko da. Honelako bazkalondo batean bertsozaleek eurek be entzuteko baino berbetako edo kantetako gogo handiagoa izan ohi dabe eta, gehienak errespetoan egon arren, nahikoa da dozenerdi bat gangartzea, bertsoak eskatzen dauen arreta giroa apurtzeko. Jentea ondo janedanda dagoenean, bertsolariari lan motza geratzen jako.

Bertso afarietan ez da hori gertatzen, arauz behintzat. Bilerarén helburu nagusia edo nagusietariko bat bertsoa bera da eta afari neurtu samarra izaten da, prezioari begiratu behar jako-ta. Batzen den jentea bertsozalea da edo gitxienez badaki zein bileratara doan eta zein jarrera gorde behar dauen. Janean ez da luxurik izango eta giroak ez dau eragiten edanean deskuidatzera, baina danak dagoz puntu bateraino animatuta. Horrela esan daikegu entzuleria ideala bertso afarietakoa dela. Izaten dira hemen be sal-

buespenak, non zegaitik edo hagaitik giroa deskontrolatzen den, baina ez dira kasu aitagarriak. Niri behintzat ez jat inoz gertatu.

Bertso afarien egitura bardintsua izan arren, tokitik tokira oso entzuleria ezbardinak inguratzen dira. Iturenen, Iruñean, Baigorrin, Hendaian, Donostian, Zaldibian, Gasteizen, Laudion, Orozkon, Bilbon, Santurtzin... hain dira gune, giro eta jente ezbardinak, ezen bakotxean inbentu barri bat plazaratzen ari zarela dirudi. Plaza agirietan be gertatzen da hori, baina distantziak bereiztasunak janazo egiten dauz. Bertso afarietan hurtasuna atxiki egiten da eta distantzi puntu bat aurkitu behar da, tribialismora ez jausteko, zeinetatik arloteria ez den urrun ibilten.

Norberak sortzen eta kontrolatzen dauen giro honetan gaiak jarrita be askotan egin dot, baina kontrola neuk dodala. Afalondo guztia gaiakaz egiteko asmoa bazekarden, eredu mistoa azaltzen eta, ahal dela, konbentzitzen saiatzen naz, ez baita gatxa afari batean alkar ulertzea, arrazoiak egon ezkero. Edo gai batzuk era indeterminatuan jarteko asmoa badago, noz eta zelan apur bat norberak antola daike, martxa osoaren barruan ondo kokatzeko moduan. Sarritan eskatu be egin izan dodaz gaiak, entzuleen espontaneitatera errenditzeak dakarzen arrisku guztiakaz. Une jakin batean atrebentzia inoportunoak gerta daitekez, baina, martxaren lema norberak daroala jorik, uste bako okerrak atoan zuzen daitekez. Ostera, entzuleen interbentzinoak minimoki egokiak badira eta bertsolariek ondo erantzun badabe, gehienean gertatzen denez, orduan saioak kolorean eta koneksinoan asko irabazten dau.

Jarritako gaiak onartu ez ezik, gai jartzaile be askotan egin izan dot, hirutik gora bertsolari direnean eta batez be bertsolari hasibarriak edo oso gazteak tartean direnean. Bi bakarrik izanda be, inoz lagunari esan dautsot: «Hi! Utziko al didak gai batzuk jartzen?». Normalean galdera hau kontestu faborablean etorten da eta bertsolariak onartu egiten dau. Badot une eder asko sortzeko bidea emon izanaren poza. Ni ez nago gaiak jartearen aurka, eta gitxiago gaijartzaile figuraren aurka; gaiak jarteko era okerren aurka



baino. Ez dago dudarik txapelketan eta gisako saioetan ia ezinezko dela zelanbaiteko gai bako formularik asmatzea. Ostantzeko ereduetan be gai jartea modalitate oparoa izan daiteke eta da. Niri gaiak jartea lan erraza iruditzen jat. Ez, noski, pentsatu barik eta kostatu barik egitekoa, baina teknikoki erreza. Gai jartzaile lana egin dodan ia guztietan lortu dot bertsolariak luzitzea. Honetaz beste toki batean berba egiten dot, baina gatxena bertso onak kantatzea da. Bertsolariari bide egoki eta luzigarri batzuk jarteak ez leuke hain neketsua izan behar, eta gitxiago hain konplikatua, oinarri minimo batzuk garbi euki ezkero. Baina, jakina, honeik garbi eukitzeko, gogoeta antolatua behar da, ez borondate on soila. Gai jartea erreza da, baina edonork ezin dau egin, ezta aurkezle be. Erreza dinodanean, batzuk hasarratu egiten dira, baina arrazoia emoten dauste. Praktikan ia edonork egiten dauenean, edo egitea bidezkotzat joten denean, ez da hain zaila izango, ezta?

## BARRIRO ERREZELOPEAN

Nire aro barri eta gozagarri horri laster etorri jakon saihetsetako bat. Berragerpena neure auzoko jaietan Lopategigaz eginda, uda edo udagoien haretan ez neban lan handirik eukiko, deirik gehienak gaidun saioetarako baitziren. Neguan eta batez be hurrengo urte barritik aurrera lortu neban neure martxa barria apur bat finkatzea. Martiaren 21ean Gasteizen saio bat neukan Sarasuagaz, izenik gogoratzen ez dodan Fakultate batean. Berrizen «Egin» eta «Euskaldunen Egunkaria» harturik, jaiton nindoan Mañarian gora, saioaren pozean. Holakoetan, Urkiolako inguru niretzat hain esanguratsuan, beti egin behar dot geraldi bat, natura harrigarriaren bizkarrean egunkaria irakurri eta parajeen miresmena gozatzeko. «Euskaldunon Egunkaria»-ren orriak pasatuz, hara non aurkitzen dodan honako artikuluau, *«Nere errezelua»* izenburuz, *Inazio Etxanizek* sinatua:

*Garai batetik ona aldaketa aundia bizi izan duela bertsolaritzak ez da dudarik. Joan den igandean lau orrialde agertzen ziren EGUNKARIAren erdi-erdian, Nafarroako txapelketa dela-ta. Telebistak ere astero badu edozein bertsozalek gustora ikusteko moduko saio atsegingarri bat. Irratian ere ageri oi dira bertsolariak eta irrati batzuetan dexente gaiñera. Ala ere, aitortu bearra dago irratiak leendik ere tarte ederrak eskaini izan dizkiola norbaitek «euskaldunon kirol nazionala» deitu zion oni. Esan bear, beraz, garai onak bizitzen ari dela bertsolaritza.*

*Nik ez det kontrakoa esango, ez naiz nor eta, baiña esan bearra daukat ez dedala garai batean aiña gozatzen bertsoak entzuten. Jakiña, normala ere bada ori, eta ez nau kezkatu bear. Nik neurea esango det bakarrik, besterik ez: Xabier Amurizaren bertso moldea ez zait gogoko. Errespeto guztiarekin esan nai det ori, noski. Gizon au jakintsua dela ezin da ukatu eta euskera oso berea duela, asko dakiela, eta bertsogintzaz ere bai, eta bertsolaritzaren istoriaz... Ori ez dago ukatzerik. Eta ez dago ukatzerik Amuriza euskaltzaleen artean euskaltzalea denik ere.*

*Baiña nik betidanik gogokoenak izan ditudanak Uztapide, Lasarte eta Basarri izan dira eta iru izen aundi oiek aipatzean ditudanean, jende askok buruan dituenak aipatzen ari naizela uste det. Eta Amurizaren bertso-moldea, dudarik gabe, diferentea da aienaren ondoan. Askoz gustorago entzuten ditut Sebastian Lizasoren bertsoak Amurizarenak baino. Lizaso da neure bertsolari eredutik gertuen dagoena. Segurtasun osoa ematen dit gizon orrek, eskuak poltsikoan sartuta eta purua erreaz kantuan hasten denean.*

*Beste bat gustatzen zaidana Andoni Egaña da. Au Lizasoren kontrakoa dela uste det ala ere. Lizaso segurua baldin bada, Egañak noiznai pott egingo duela ematen du, nola segitu ezin asmatu totelka asi bear duela eta lotsa-lotsa eginda eszenariotik aldegin burumakur. Baiña ala ere, tak eta tak, bota egiten ditu bereak eta grazi aundiz gaiñera beti.*

*Eta aipatu det itza eta ori da gaurko bertsolariei (neure uste apalean) falta zaiena: grazia. Orixe da behintzat nere errezelua.*



Durditurik geratu nintzen. Barriro honetan hasi behar al dogu? Heurt eta dana popatik hartzera bialtzeko gogoak emon eustan. Txapeldun izan nintzenetik hainbat urte igarota, pare bat urte isiltasunean erretiraturik eginda, bertsolaritzaren zirkuito nagusitik kanpo nengoela, ia berrogeta hamar urte bizkarrean nebazela, ondino be «gaurko bertsolaritza» nire izenagaz identifikatzeko maniaren plazara itzuli behar al neban? Bide baztarretik ibilten be ez al dauste itzi behar? Artikuluaren xedea ez zegoen ulertzerik, nire berragerpena zapuzteko klabean ez bazen, harrera onen bat edo arrakasta apurren bat izango ete neban bildurrez, antza.

Inazio Etxanizek, aurreragoko hiru izen klasikoez ganera, gaurkoetan hiru bertsolari aitatzen dauz: Lizaso, Egaña eta ni. Beste bientzako goralbenak neuk be badakit egiak direla, Etxanizek baino hobeto. Baina honeik halako dohaiak eukita, zelan esan leiteke «gaurko bertsolariei falta zaiena: grazia» dela? Hirutik bik baldintza egokiak betetzea ez al da proportzino bikaina, jardun bat osasuntsu dagoela etarateko? Egilearen intentzinoa ez dakit zein izango zen, baina, artikulu honen mezu bakarra izen bat deskalifikatzea ez bazen, arrazoibidea ez da inondik sostengatzen. Somatzen dot Etxanizi zer gertatu jakon. Egun baten entzungo eban Amuriza erretiratu egin zela eta poztu egingo zen. Oraintxe be askotan itauntzen dauste: «Hi ez al hintzan, ba, erretiratu?». Ez neban uste deserretiratzea hainbeste kostako zenik. «Amuriza barriro kantuan hasi ei dok». Etxanizek horixe ez eban, antza, itxaroten eta bide erdira urtetea pentsatu eban, aro barriaren pozean errezelo zaharren lakiotik jarein ez neinten.

Gasteizera ez nintzen bape animoso heldu, batetik zaplastekoaren eragin orokorragaitik eta bestetik Gasteizko bertsozaleek artikulua irakurria izango ebela pentsatzen nebalako, normala baita hango bertsozale posibleen egunkaria «Euskaldunon Egunkaria» izatea. Gasteizera iritsita, jentez betetako areto luze

baten aurrez aurkitu nintzen. Fakultate bat edo horrelako zerbait zen. Antolatzaileak harriturik zegozen hainbeste entzule ikusita, batez be gazteak. Sarasua erdi gaixorik agertu zen, sukar eta guzti.

—Jota nago. Eztakit zela etorri naizen be.

—Hi! Ba, hemen zeozer ein biherra jjaok. Jente guztioneri ezin jjotsau marro ein.

Erantzukizun guztia norbere gain hartu beharreko uneak larriak izaten dira. Han ez dago gai jartzaileari begitzerik edo taldean babesterik. Lagun soil bi eta bakar, dana egiteko. «Zegaittik ez ete nok Urkiolatik etxera joan?». Ez dakit Sarasuak zer barrukera zeukan, segurrenik gogoratu be ez da egingo, harentzat saio bat gehiago izango baitzen, baina niretzat berragerpena zen, hain entzuleria handi eta kualifikatuaren aurrean, hirietako bertsozalea oso gaztea eta kontzientea izaten baita gehienean. Eta hara, erdi derrotaturik hasita, saio garaileak urten ebala, entzuleen ustez behintzat. Neure pozean kabitu ezinik nengoen eta bueltan, gauerdi lainotsuan, San Antoniori turutaka pasatu nintzen Urkiolan ganetik.

# 10. Albora-martxa

## LIBREAN ETA NEURE MODURA

Aitatu artikuluaren musturrekoa ahaztu ez jatan egin, baina ibileraren jareintasunak laster itzi eban muzinkeria anakronikoen kutxan. Izan be, dozenerdi bertsolariko saio batean baleiteke, entzuleen sektore batengan konkurritzea batetik moltzoaganako interes orokorra eta batzukanako sinpatia berezia eta bestetik nonor jakinaganako muzina. Horrelako saioetan badakit aurrean dagoen entzuleria ez dela nigaitik etorri. Bertso afari baten, ostera, bertsolari bi bakarrik izanik, gatxa da bietariko bat (moltzoaren erdia) desbegiko jakon entzulerik inguratzea. Okerrenean be, indiferentea izan daiteke, baina nekez arriskatuko da berari gozamen negatiboa emango dautson bertsolari bateri hainbeste bertso entzun behar izatera. Beste motibo batzukaitik hurreratu beharra izan badau, (laguntaldea, alkartea, ekimen kulturala, edo soilki beste zer egin jakin eza), mahai inguruko hurtasun pertsonalagoak eritxi baikorrera eroan daike, batez be entzuleria hunkitzeko moduko saioak urten badau. Plaza librean be, bi edo hiru bertsolariren arteko saioan, nekezago gertatuko da jarrera destainosorik. Zirkunstantziakaitik han aurkitu direnak, edo alboratu egingo dira, tabernara edo dana dalakora, edo kortesiaz entzungo dabe, eta orduan hemen be, plazaren gustoko saioa izan bada, bera be sinpatia orokorrak atzemana izateko arriskuan dago. «Egia esan behar badiat, ez hintzen nire faboritoa, baina ez nian uste horrelakoa hintzenik».

Karteleko jaialdi handietan askoz gatxagoa da honelako erreakzinorik sortzea, bakotxak oso gitxi kantatuz ganera, mol-

tzoa baita inposatzen dena. Entzule bakotxak bertsolari bakotxari buruz saio hasieran daukan eritxia bera nagusituko da azkenean be, norabide berean indartua, izatekotan. Gazteak, eta saio batzuren ondorioz, aisago irabaz daike ondino berari buruz posizionatu bako entzulearen begia, baina nik, Euskal Herriko txapeldunaldi luze bitan artikulu horretako kalifikazinoa besterik lortu ez neban entzuleakan nekez itxaron neikeen aldakuntzarik, ia berrogeta hamar urtetan gora ninoala. Plaza handi eta formalizatuen kargatik askaturik, bertsolaritzak betidanik izan dauen maila direktoago eta osoago honetan eztitan nenbilen. Hamarretik zazpitan sentsazino triunfalez itzultzea lortzen neban, beste baizpairutan gustora eta bat edo bitan hala-holan, baina oso desgustura ia inoz be ez. Gaiak jarritako saioetan guztiz alderantziz gertatzen jatan proportzinoa ibilera barrian lege bihurtu zen. Artean lan eta eginkizun izan nebana orain dibertsino eta asekizun gertatzen ari jatan. Aurretik be baneban, noski, bertsolaritza honen esperientzia ugaria, batez be txapeldun izateari itzi neutsonetik honantz, baina beste saioakazko aldiberatasunak nahaste deserosoa eragiten eustan.

### PUNTAKO SAIOAK

Larogeta hamarreko Araba-Bizkaiko txapelketaren ondoren, oso gogoan dot zer proposamen eroan neban Mungiako bertso eskolakoen batzar batera. Eurek be gogoratuko dabela uste dot. Batzarra eta osteko afaria noz zeuken galdeturik, neu be joateko baimena eskatu neban eta pozik onartu eben. Araba-Bizkaiko txapelketari buruzko zenbait gogoeta egindakoan, neure gai zentrala aurkeztu neutsen. Ideia zelanbaiteko «puntako saioa» zen, non bertsolari teorikoki puntako bik, buruz-buru eta denporaren muga barik, euren ahalmen guztia husten ahaleginduko ziren, hatarako berariaz batutako entzuleen aurrean. Ideia haretan, saio libreaz ganera, gaiak be sartzen ziren, non bertsolariak txapelketan lako intentsitatea eta zailtasunak asumituko ebazen. Jatordua ez zen nahitaezkoa, baina argi zegoen, saio asegarria eta lasaia, dana batera barik ekitaldi bi edo hirutan burutzekoa, izango bazen, bazkari edo afari baten inguruan atondu behar zela.

«Puntako saioaren» ideian osagai bi zegozen nire buruan. Alde batetik bertsolaria daukan guztia emotera mentalizatzea, txapelketan lez zelanbait, baina aldarte nasaiagoan, eta bestetik bertsozaleak asealdi on bat, bertsozko asasku bat hartzea. Ideia ha Mungiako eskolakoen aldetik oso ontzat eta gogoz hartua izan zen eta uste dot bertan erabagi zela estreinakoaren eguna eta protagonistak. Bata neu, proposatzailea nintzen aldetik, eta besteak halako erronka baterako atxakirik ipiniko ez ebana izan behar eban. Azkenean Peñagarikano hautatu zen eta halantxe egin genuen, handik ez dakit zenbat egunetara, dalako «puntako saioa», Gamizko alkartean, hirurogeta hamar bat lagunen aurrean eta afal osteko patxadan. Ondino «bertso afari» izenik ezarri ez bajakon be, saio ha bertso afari garbia izan zen. Ez naz tematzen hasiko lehenengo «bertso afaria» izan ete zen ala ez, baina argi dago, modalitate hori abian izan balitz, jakitun egongo nintzela eta Mungiako eskolakoek ez ebela nobedadetzat hartuko. Dana dala, inbentuaren asmatzaile edo asmatzaileetariko bat banazela sinestu arren, ziur nago nik ez nebala izena asmatu. Ez dakit nongo eta nozko programa batean, halako saio baten izenburutzat, «bertso afaria» agertu zen eta behingoan zabaldu zen Euskal Herri osoan. Hain izen egoki eta adierazkorraren asmatzaileari pozik bialduko neuskioz gabonetan kerixak, bere burua agertzeko gogorik baleu. Segurrenik asmatzailea ez da gogoratu be egingo. Herriren bateko talderen batean, saioa kartelean zelan kalifikatu pentsatzen hasiko ziren, baten batek «bertso afaria» botako eban, haxe aurrera joango zen eta hara non modalitate barri bat betiko bataiaturik gelditu zen.

## GAZTEAKAZ

Kontatzen dihardudan 1990. urtetik honanzko ibilera gozatsuan, (gaijartzedun jaialdiei albo egitean, saio gitxiago neukan, baina askoz intentsoagoak) gazteakazko lankidetza handia izan dot. Ia gehienean gaztea ipinten eusten laguntzat, sarritan neska bat, eta ez gitxitan oso lagun gazteak, bertsotan ondino nobato samarrak. Behin baino gehiagotan entzun izan dot: «Hi gazteakaz majo habil, eh?». Auzi garrantzitsu honek azalpen txiki bat merezi dau, beti be neure ikuspegitik, jakina. Egia da gazteakazko ibilera abantaila bat dela, baina ez guztiz. Gazteakaz konektatzeko modukotzat hartua izatea lausengarri da beti be, baina nik badakit ez nazela gaztea eta hortik ez nau salbatzen «gazte sentitzearen» falaziak. Alde batetik daukadan adina, hots, une honetantxe daukadan adimena sentitu nahi dot, eta bestetik gaztetasunaz ez daukat bere sentipena barritzen saiatzeko moduko nostalgiarik.

Bertsotara noanean, nire grina nagusia bertsoa bera da. Nogaz eta nori garrantzitsua da, noski, baina danen ganetik bertsogintza bera da nire desiragai. Ez jat hainbeste ardura laguna gazte, adinkide ala zaharrago izatea, neurri bariatu batean danerik gertatzea baino. Bai laguna, bai entzuleria, izaera ezbardinekoak aurkitzea zortetzat joko neuke, baldin laguna, adinez at, bertsolari egina bada. Orduan adinkide bat ala gazte bat laguntzat euki, dialektika ezbardinak sortzen dira edo sortzen laguntzen dau.

Baina gaztea ondino promozino mailan dabilena bada, oso egoera diferentea gertatzen da, entzuleak haregazko jarrera animatzailea, zelanbait paternalista hartzen dau eta norbera be neurri handi batean aitabitxi lana egin beharrean aurkitzen da. Nik zeregin hau maite dot eta saio kopuru orokorraren barruan honelako mordo bat atseginez asumitzen dot, baina aitabitxi lanean espezializatzeak ez dau nire desiragai nagusia betetzen. «Hi! Halako eta halako saio bat antolatu gura yoagu bertsolari gazte batzukaz. Etorriko al hintzateke?». Edo: «Hi! Halako ospakizuna yeukagu eta etorriko al hintzateke gazte bat edo bi hartuta?». Honelako saio promozinozkoak edo esperimentalak gehienean diruz be urriak izaten dira, hori ugari izatera, beste izen batzuren eskea izango baitzen. Orduan neure burua zerbitzu baten emoiletzat gehiago ikusten dot eta gustura, noski, baina ibileraren zati handiegi bat horretara mugatzea neuretzat be zapuzgarri da.



Bertsolari egina izateak ez dau esan gura oso ona izan behar dauenik eta gitxiago elitekoa. Bakotxak daukan maila daukala, behar dena da entzuleak ez dagiela egingaitzat edo goragaitzat har, errealitate burututzat baino. Badira gazteak, betiko hobakuntza edo okerkuntza posibleak albora itzita, edonogaz buruzburuko maila autortzen jakenak eta entzuleak halantxe ikusten dituenak. Baina normalean hogeta bost bat urtez beherakoetan autorpen hori daukenak oso banakak dira. Beste guztiak promesa mailan dabiz eta, adin batera iritsita, gehienek edo bertsolaritza aktiboa itzi egingo dabe, edo maila lokalean egokituko dira. Heltzeko tokira heldutzat dagozen bertsolariakaz ez nau hainbeste arduratzen lagunaren adinak edo mailak, neure uneak eta ahalmenak baino. Neure burua indartsu ikusten badot, ziur nago saio onak urtengo dauela. Gero beti halan gertatuko ez bada be, konfiantza horixe eroan ohi dot eta gehienean gertatu egiten da. Saio libreko kasuan nabil, jakina.

Halan be, horrek ez dau kentzen, ahal dela, neu baino hobeakaz kantatzeak abantaila handiak eukitzerik. Orduan erantzukizuna banandu egiten da eta, norberak ez bada besteak ezpala atarako dauelako ziurtasunak beste jagitasun bat emoten dau. Azken batez, aukeran emonik, argi dago izen handiakaz kantatzea nahiago neukeela, ehuneko berrogeta hamar batean behintzat, proportzino bat izentatzeagaitik. Hori horrela izanik, ganerako saioetan konbinazino posible guztiak estimatuko neukez, zenbat eta bariatuagoak, hoba. Baina kontua da ez jatala proportzino horretako zorterik egokitzen. Gero eta kondenatuago aurkitzen naz helburu baten aldeko zerbitzuak eskeintzera edo, ber-

tsoa bera helburu denean, aitabitxi lanak egitera. Militantzia onartzen dot, bultzatzen dot, harrotzen nau bertsolari militantetzat hartua izateak, baina, agendari begituta, militante «bertsolaritzat» gelditzen ari nazela ikusteak ez daust bape tiratzen, dana bertan behera iztera sakatzen baino.

Gazteakaz ondo konpontzen nazela entzuteak lausengatu egiten nauela argi itzi ondoren, badot beste zehaztasun garrantzitsu bat egin beharra. Ez da hainbeste adin kontua, bakotxaren mundu bibentziala eta kontzeptuala baino. Orain gertatzen da gazte gehienak, danak ez esatearren, karreradunak edo dabizenak direla. Gazteak beti egon dira, baina bertsolaritzan oraintsu arte pentsakera gehienbat rurala eta mugatua izan da. Hogei urteko bertsolari «klasikoa» esan geinkeena.

Joan den hamar-hamabost urtean bertsolaritza gaztetzea baino fenomeno ebazgarriagoa izan da gaztetasun eskolatua izatea. Hortxe dago gorabehera nagusia eta nik metamorfosia oso barrutik bizi izateko eta gozatzeko zortea izan dot. Jatorri guztiz ruralekoa izan arren, estudiante izana naz eta baneban mundu kontzeptual oso garrantzitsu bat, hamaika urteko umezarotik gaztaroan zehar barnatua. Mundu hori bertso eskoletan edo euskaldun barrien aurrean (honeik gehienean eskolatuak dira) garatu neikeen, baina ohiko bertsolaritzan ez. Orain hogei urterarte inor gitxik esango eustan Marxen, Aristotelesen edo Moustakisen antza neukanik eta gisako hamaika metafora. San Pedrotik edo Kaputxinotik ez ginen pasatzen. Edozein karrera egin dauenak naturaltzat daukazen hamaika kontzeptu orokor eta arrunt, gaur bertsolaritzan normal dabizenak, orain urte batzuk pentsagatxak edo gitxienez inoportunoak ziren.

Bertsolariak ez ezik, entzuleak be, gaztea den heinean, erreferentzi mundu zabalago hori eguneroko ogia lez asimilatzen dau. Orduan bertsolari gazteek, eta jada hain gazteak ez direnek, neure baitan neroan mundu ha guztia bertsotara atarazo dauste eta horretan argi daukat, asko ikasiz ganera, (bertsogintzaren inertzian erreferentzi munduak naturalki aldatzea ez da astebetean lortzen), bertsolaritzako satisfazinorik handienetakoak hartu dodazela. Ez dot esan barik itzi gura gazteek (baita neuk be, karreradun izan nazen aldetik) mundu ruralaren abantaila eta baliabide asko galtzeko arriskua daukela. Galdu dabela esateko era bigun bat. Beraz, ez da hainbeste adin kontua, bertsolari bakotxaren hornimen intelektuala baino. Hortxe gertatu da bertsolaritza modernoan aldakuntza nagusia eta masiboa, ni berandu samar harrapatu nauena. Gazteria eskolatu bakoak, adinaren berezko kidetasunez ganera, beteraniari gradu bat emoteko joera daukan bitartean, gazteria eskolatuak ez dau adindunen preminarik ezetako sentitzen. Hau, jakina, bertsolariez baino gehiago entzuleez dinot, ze ez da egongo maila handira heldu den bertsolaririk, tradizinoaren eta aurreko sustraien kontzientziarik ez daukanik, oso jente mota ezbardinen aurrean defendatu behar dauelako baino ez bada be.



Tren hau martxan harrapatu ahal izan dot eta orain, badoala ikusteak pena damostan arren, sosegatzen naz pentsatuz bizitza bakarrean ez dagoela tren guztiak harrapatzerik. Badira geltokiak, nora trenik inoz iristen ez den, eta badira trenbide alboak, luzeak eta edonorakoak, non trenak ez dauen inoz geltokirik aurkitzen. Nire geltokian tren asko gelditu da eta ez daukat kexatzeko motiborik, baina badirudi iristen ari dela trenbide albora mentalizatzeko sasoia, non trenagazko kontaktu posible bakarra bera ganetik pasatzeko moduan luzatzea den. Ez gagoz hainbesterako! Bertsolaritza nire bizitzako trenetariko bat baino ez da.

## Saio intentsoagoak

1990ean hasi eta laubost urteko bolada trinkora itzulita, plazan be saio batzuk egin izan genduzen, «puntako saioaren» filosofiakoak, halako buruz-buruko desafio antzekoak. Amalloko jaietan urte baten Peñagarikanogaz eta beste baten Egañagaz, esatera-

ko. Hasierako agur eta buelta batzuz aparte, beste guztia gaiak jarrita izango zen, txapelketan ohi diren mota eta zailtasun guztiakaz, kartzelako gaia barru. Saio geldien lekuan, tabernarik taberna ibiltari be bai (Orozkokoa datort gogora Peñagarikanogaz), edo kalerik kale, Ondarroan, adibidez, Lizasogaz behin eta Egañagaz beste behin. Kalekoa eta tabernetakoa arriskutsuago da eta inoz ezetza emon izan dot, baldintza fidagarririk somatzen ez neban zenbait lekutan, baina ondo urten ezkero, batzuk urten euskuen moduan, ikaragarrizko zirrara lortzen da.

Deustuko bat ez daukat ahaztua, Iturriagagaz. Bertso afariaren aurretik kalejira bat nahi eben trikitilariakaz. Heldu ginen eta justu orduantxe barrikada batzuk sutan zegozen eta «baltzak» egurra banantzen hasi ziren. Herrikoan, gaztetxean eta beste taberna batzutan be sartu ziren eta alde guztietako triskantza zebilen han. Halan ez zegoen ezertan hasterik. Orduerdi baten buruan, kaleek ibilgarri zirudienean, abiatu ginen martxan, trikitilari bikote gaztea joten eta bertsolariok atzetik. Inguruan etorri beharreko gehienak sakabanatuak ziren eta geratzen zirenak espaloitik eta baztarretara adiago jarraitzen eben. Han ginoazen kale erripe batean behera, tibiri-punbara, bonbaketan inozentziatik sortutako panpina intenporalak lez. Gaztetxe azpiko kantoian furgoneta pilo bat eta «baltzak» asalto posizinoan aurkitu genduzen. Gure bat-bateko agerpen idilikoaz txunditurik behar eben, pare bat metrora, tibiri-punbara, zirkunstantzien inexistentzian pasatu ginenean. Ez zeikien itxarona izan halako erriturik musturretara etorterik eta errespetoz jasan eben. Geu be ez ginen bila joan, baina bat-batean topo egin genduen eta kontrasteen intersekzinoan geure martxari inozenteki jarraitzea besterik ez zegoen. «Mira esos cabrones!» entzun neban alboan. «Unai! Entzu'ok hori?». Errituak garaile urten eban.

Orain frakismoan gagoz. Meliton Manzanas akabatu barri da eta ETAren indarra nabarmenki gora doa. Herri batean, bideko inkontru baten ondorioz, komandoak ihes egin dautse. Bik



mendirantz hartu dabe eta bat, zauriturik nonbait, kale bitartean ezkutatu da. Mendia otsoentzat itzirik, kalekoa jazarten dabe. Koartela ez dago urrun eta atoan inguratzen dabe dana, eleiza artean dela. «Etxe moltzo honetantxe egon behar dau». Eskuliburu polizial guztietan irakasten diren urratsen arabera, setioa estutuz doa, presa barik, baina segur, etxeak astiro eta bananbanan arakatuz. Hatan, eleizako ate nagusitik mutiltxo batek, seizazpi urtekoak, txilin joka urteten dau eta atzetik abade batek, bere solemnitate zuriz, humeral beilegian kopoi santua daroala. Kaleko kristinau banakak, Gure Jauna pasakeran, belaunikatu eta aitaren egiten dabe, beste eskuliburu batzuk oso zehatz irakasten dabenez. Goardia zibilaren esentzia katolikoak bere eginkizunean geldiune reberentea egingo dau. Ez da belaunikatzen, baina akolitoaren txilin hots maizkorra parean gertatzen jakon numeroak buru-makurtze errenditua eskeintzen dau. Abade-akolitoak kalean behera ezkutatu dira, gaisoei Gure Jauna banantzera, beharbada hilurran bateri azken sakramentuak emotera. Horixe da goardia zibil ofizioz fededunak pentsatu dauena, baina abade ha iheslaria izan da, kopoia barik arma estalia zeroana, gauzak okertzen baziren. Esku artetik hain iheste baketsuaren prestakuntzak eta konplizitateek osotuko leukien atal suspentsezkoan luzatzea bertsolaritzatik urrun lihoake. Abade batzuk holako zerbitzu terrenalak be eskeini behar izaten ebezen.

Azaltzen niharduen saio intentsoagoetara itzulita, ideia honeik ez dabe arrakasta handirik izan, baina nik neuk gehienen oso gomuta gihartsua daukat. Gogoko dot saio batek zelanbaiteko tentsino iragarri bat euki dagian, entzuleak jarrera espektantean etor daitezen. Horrek animatu eta estimulatu egiten nau eta emoitza espektazinoaren araberakoa izatera hurbildu bada, poza biderkatu egiten da. Jardunok ez dodaz inondik be erizpide esperimentalean planteatzen, inoz nigatik esaten izan dela entzun dodanez, jarrera naturaltzat baino. Bat-batean zein gaiakaz, saioari emozino erantsi bat bilatzea bat-batekotasunaren izaeratzat, errutina-

ren astingarritzat joten dot eta errutina era askotara gaindi daiteke. Ez beti eta sistematikoki, noski, eta are gitxiago ganora barik, inoz eragiten diren pailazokeriakaz, baina ohiko saioen inertziatik txapelketaren urduritasunera bitarteko zelaiek bertsolaritzaren ospea eta kalitatea areagotu egingo leukie. Erronka honeitan dana dalakoagaitik txapelketara ez doazenek edo joateari itzita dagozenek bardin eta beharbada gogotsuago joka leikie.

Sebastian Lizasok eta biok telebistan egin genduen ordubeteko saioa beste adibide bat izan daiteke. Programa hari burrundada handia emon jakon eta, egia esan, azkenerako ia txapelketa baino konpromiso latzagoa gertatu zen, niretzat behintzat. Halan be, baietza emon genduenean, ohartzen nintzen zer etor zeitekeen. Belokigaz alkarrizketa batean, —bertsolaritzaz mahaingururu bat edo zela uste dot —, desafio kontuek urten eben, lehenago egiten ei zirenak, orain egiten ez direnak eta abar. Hatan, galdetu euskun, segurrenik ondoriozko saio bat probokatzeko intentzinoz: «Zuek egingo al zenukete horrelako buruz-buruko luze bat?». Nire aldetik erantzuna dudabakoa izan zen: «Zergatik ez?». Lizasok be halantxe hartu eban eta ganerakoa eguna eta plaza izentatzea besterik ez zen.

Programak, guztira, ordu eta lauren hartuko eban eta gure erronka zen ordubete jarraian kantari egitea, ganerako denpora han batu ziren komentaristek beteko ebelarik. Ni neure aldetik denbora guztia kantuan agortzeko intentzinoan nenbilen eta haxe egingo genduen, Lizasok, atzetik zeinuka ari zirela-ta, amaitzea erabagi ez baleu. Ezusteko bitxia izango zen, zuzeneko programa batean, denpora guztia gainditu eta aurkezleak derrigorrean amaiarazotea, burruka oilarrak apartatzen lez. Saio batean, luzetasuna askori harrigarri iruditzen bajako be, kakoa ez da denpora, zelakotasuna baino. Ordubete zein ordu lauren izan, kalitatean datza zailtasuna. Ustez maila onean eta etorritsu sentitzean, amaitzea jarraitzea baino gatxago izaten da. Niri behintzat horixe gertatzen jat.



## ITURENGO AURTITZEN

Bizi guztian egin dodan saio jarraiturik luzeena Iturengo Aurtitz auzoan izan zen. Esnal izeneko donostiar gazte batek Aurtizko jatetxea hartua eban eta berak deituak izan ginen Lizaso eta biok, eguerdiko saioa pilotalekuan eta gero han bazkaltzen gelditzeko planean. Lizasok alde egin behar izan eban eta ni bertan geratu nintzen. Bazkaltzen Esnalen Usurbilgo laguntalde bat bildu zen, niretzat ezezagunak danak, Iñaki Agirresarobe «Tola» izan ezik. Bazkal ostean, baten urteak zirela-ta, otzara batean txarrikume panpintxo bat atara eben. Taldekoek bertso bana edo kantatu behar eutsoen zorionduari eta nik be, tartekoa izan ez arren, besteen katean bertso bat bota neban. Lau ginen zorion bertsoa kantatu genduenak. Bigarren bueltan jarraitu egin eben eta ni be ez nintzen gitxiago izango. Bat oso justuan zebilen eta hirugarren bueltan erretiratu egin zen. «Tola» be, beste hiru-lau buelta eginda, isildu egin zen.

Nikolas Izeta zen laugarrena eta honek ez zeukan geratzeko konturik. Nik ez neban ezagutzen, baina bertsotan solte eta gatzez egiten ebala nekusen. Bera isildu ezik, nik be, bertsolari gisan etorria izanik, ez neutson erizten amore emoteari eta segi. Ekin eta segi eta segi eta ekin. Saioa nahiko zelebre zihoan, nonbait, halako batean grabagailua aurrean jarri baiteuskuen. Ordurako ordubetetik gora generoan. Zinta alde bietatik beteko zen eta guk segi. «Dios!» —pentsetan neban —. Hik amaitzen ezp'ok, neuk be ezin jjoat ein, ba!». Arratsaldea oso aurrera zihoan eta tarteka jentea sartzen zen jantokira. Egotaldi bat entzuten eginda, alde egiten eben. Batzuk urten, beste batzuk sartu, gure mahaikoez beste entzulerik ez zen falta. Batzutan konturatzen nintzen sartzen zirenak lehenago entzuten egonak eta joanak zirela eta, ez dakit katxondeoz ala harriduraz, keinuak egiten ebezen, esaten lez: «Oraindik ere hor ari al dituk?».

Ordu bi igaro ziren eta inork ez zeukan lagunari azkena

izaten izteko konturik. Hiru ordu bete ziren eta segi, Galiziako sagardotegietan zehar Fraga bisitatuz, astoan, taxian, hegazkinean, submarinoan, nik al dakit nondik eta nora ibili ginen. Ez dakit zenbat denbora izan zen zehazki, baina hiru ordutik gora kantuan ekin geuntson, doinurik aldatu barik. Zorion bertso kortesiazko batetik hasita. Niretzat guztiz ezustekoa izan zen, gehienak ez bainebazen ezagutu be egiten. Otzarako txarritxoak jarraipidea emongo eban, baina gero, tira honantz, saka harantz, «egunari itzulia larogei mundutan» lakoa izan zen ha. Hasieratik azkenerarte tinko eutsi eutsoen entzuleek bizirik urten eben abenturatik eta ganera zinoen halako esperientziarik ez ebela sekula bizi izan. Neuk be ez! Urteak igaro dira eta oraintxe be, alkar ikusten dogunean, atrakada ha gogoratzetik ezin naz libratu.

Azkenean, nonoz, ez gitxi kostata, etxerantz abiatu nintzen, gauerdi inguruan. Laguntalde ha bertan geratuko zen bigarren gaupasan. Etxe kontra baten zegoen autoa alperrik abiarazo neban. Ezin neban urtenbiderik aurkitu, zirritu guztiak kotxez eta lanroberrez itxita. Kalexka mehar batean sartu nintzen eta, gertagarri zenik pentsatuko ez nebana, bidea autorik ez kabitzeraino estutu zen. Etxeak mogitzen hasteari baino atzeka joteari ez-gatxago eritxi neutson eta, lantzean arrastada mingarri bat entzunez, kabuen la dana dala!, lehengo lekura bihurtzea lortu nebanerako, umorea galtzeko arriskuan nenbilela konturatu nintzen. «Hor konpon! Ego'ai berton!». Gaztez beterik zegoen taberna batera sartu nintzen eta «aupa, Amuriza!» eta «bota bertso bat!», han nengoen musika eta burrundapean, zer gertatzen jatan azaldu ezinik. Nozbait ulertuazo nebanean, orroaka hasi ziren:

—Non duk autoa? Bizkarrean aterako diagu!

—Neu barruan naizela?

«Hemen erremedijjoa gatxa baiño okerrao ixen leikek», pentsaturik, mila esker eta abar, «ez, ez! bakarrik ere aurkituko diat!», autora itzultzea lortu neban. Osoago egongo zen geldi eta preso, askatzearren aidean baino. Patxadaz hartzea erabagi neban. Noan lehengo jatetxera eta lehengo lagunakana.

—Aibadios! Berriz hemen? Damutu egin al haiz?

—Beste halakoxe saio bat egin gabe joateak pena eman zidak.

—Pentsatzen genian, bai, bildurtuta alde egin ote huen.

—Nahita ere ezin diat joan, ba! Autoa preso zagok eta, oinez abiatzeko, etxea urrunegi ikusten diat.

—Ez haiz makala, ikusten baduk.

—Zuek oraindik ez zineten begiratzen ere hasiko.

—Hemen jendea gau osorako etortzen baita.

—Gero ere ez dituk denak batera abiatuko.

—Laster aterako diagu kotxea, ifernuan ez badago.

—Ez dik merezi. Inguruak libratu arte itxarotea zaukak. Arrastada batzuk hartu ditik, baina ez diat uste nerbioso jarriko denik.

Ordu txikiak martxan izango ziren, auzotik urten nebanerako, ez baztarrei barriro ikutu barik. «Agur, Aurtitz! Banajjoak txinpartak jaurtiz!».

## KONFIANTZA KONTUA

Saio intentsoagoen harian, bertsolaritzan sakonagoko arazo bat dago, konfiantza kontua esango neukeena. Bertsolariaren irudi tipoak, urtekeran, egokeran eta kantakeran, jarrera defentsiboaren ezaugarrietatik gehiago dauka, konfiantza garailetik baino. Oholtzarantz bidean, gehiago dirudi lan bortxatuetara doan taldea, arrakasta baten inkontrura baino. Ustez saio onak urten badau, orduan poz doblea izango da: «Hi! Zerbait bagaituk, eh!». Alegia, «leku onetik libratu gaituk!». Hurrengo saioaren ataria barriro be lan bortxatuena izango da. Mahaian dagozenean, gehie-

nek gurago dabe jesarrita kantatzea eta, mahaipetik ahal balitz, hoba. Entzuleek norbera eta norberak entzuleak ondo ikusteko modua dagoenean, pasa liteke, baina gehienean, lagun moltzo batetik gora, gatxa da ondo ikusi zagiezen, samak luze-luze eginda, eta zeuk bardin ikusi dagizuzen.

—Zergatik ezkutatu behar diagu geure burua?

—Ez duk ezkutatzea, lasaiago kantatzea baizik.

—Entzuleek ondo eta eroso ikusi ezin bahaute, esango didak ezkutatzea zer den.

—Niri ez zaidak ateratzen zutik kantatzea.

—Niri ere ez eserita. Hor konpon!

Honelako eztabaidak sarritan izan dodaz. Orain ikasi dot gogoak eta momentuko zentzunak emoten daustan moduan jokatzen. Bakotxak egin dagiala barruak emoten dautsona. Horretan kubanoek eta ezagutu dodazen beste inprobisatzaileek, publikoari zerbait eskeintzeko trebetasuna daukan edozein ofiziok lez, jarrera jagiagoa erakusten dabe. Badakit oso izakera eta estilo diferenteak dagozela eta on dela egotea, baina beti be publikoari aurre emoteko gailentasun batetik. Aktorerik estatikoenak be ondo ikusia izateko konfiantzatik berba egin behar dau eta are gehiago kantariak. Gauza bat da dibismo edo triunfalismo txotxoloa eta beste bat entzuleria abordatzeko aire minimoki garailea, arte publiko guztiek garatu dutena. Edukiak eta formak, biek egiten dute entzun-ikuskizuna.

—Bistan dok pulpitutik predikatzen ohituta hagoela.

Besteek eten barik gogoratuko ez baleuste, abade izanaz daborduko ahazturik nengokeenaz ganera, sekula ez naz pulpitura igon, baina ezta jesarrita predikatu be. Erlejino kontuez harago, gauza jakina da eleizek oso akustika ona daukela eta pulpitua goian egotea oratoriaren oinarrizko arauetan datzala. Eleizatik kanpora, eskenatokiak zeozergaitik egoten dira altuera batean eta



publikoaren zorua zeozergaitik egoten da behera eginean, jenteak ondo eta eroso ikusi ahal izan dagian. Badira, noski, jesarrita kantetan edo joten dabenak, baina altuera batetik beti be. Entzulea gorago egon daiteke, goi-palkoetan, pilotalekuetan, zelaietan gertatzen denez, baina ikusmira ondo bereiztuan. Hau ezinezkoa da pareko planoan lortzea, oso jente gitxigaz ez bada. Aktuatzaileak, ondo jarraituko bajako, bistan eta goi egon behar dau, baina altueran paretako, burua altu eta barrua gailen sentitu behar dira. Sobera jakina da gure zentzumenen alkar-erlazinoa, batez be ikusmen-entzumenena. Ikusten ez denaren ahotsari, hain ondo ez ulertzeaz ganera, arreta gitxiago ipinten jako. Nonoren hitza entzuten dogunean, gure burua tak biratuko da harantz eta ez da trankilduko begiek ahotsaren etorburua aurkitu arte. Betaurrekoak kenduta dagoenari deitzen bajako, lehenengo erreakzinoa eurak jaztea izango da. Nik irakurteko kendu egiten nebazen eta behin espetxean gogoan daukat zelan esan eusten, behin eta barriro obserbatu ondoren:

—Hi, Jabier! Deijje entzukeran, zegaittik jazt'ozak beti betaurrekoak?

—Entzuteko!

—Betaurrekoakaz entzut'ok ala?

—Zegaz etxakiat, baia eurok barik etxoat ondo entzuten.

Lagunek barre egiten eben, baina betaurrekodunek zein hainbakoek entzumena ikusmenagaz lotuta daroagu. Naturarik oinarrizkoenaren ebidentziak dira honeik. Zer esanik ez, jardunari «aktuazino» maila emon gura jakonean, sarritan hatarako jazkera eta guzti. Zelanbaiteko uniformeak eskaintzaren bikaintasun bat iragarten dau eta horrek aginduan huts egiteko arriskua daroa. Euskaldunen izakerari ez ei dagoko betetzea seguru ez den berbarik emotea, baina bai, dinot nik, inork uste barik bete dauenaz harrotzea. Hau ez da euskaldunen izakera kontua, giza grina orokor batena baino. Edonor baizen garaipen zale gara, baina

beharbada porrotaren bildurrago. Bertsolaritzak irudi aldetik erakusten (eta baloratzen) dauen modestia ez dakit apaltasunaren aurkia ala harrotasunaren iruntzia den. Bata zein bestea izan, (segurrenik bien nahastea), azpian segurantza kontu bat dago. Behar besteko konfiantzarik eza.

## ANJE DUHALDEGAZ IBILERA

Aro honetako jardunik gogoangarrienetakoa Anje Duhaldegaz ibilera izan zen. 1990ean «Anje Duhalde Amurizaren kantari» diskoa atara genduen, non, bertso sorta guztiez ganera, bederatzi doinuetatik bost nireak diren eta lau Duhalderenak. Kantatzearen eta moldaketa guztien ardura berak hartu eban. Ez zen behingoan burutzeko lana izan. Eztarritik operatu barri eta perspektiban isilaldi luzea nebala egin neutson proposamena. Gogoan dot zelan ume esperoaren bigarren hilean gengozen, esan neutsonean, «Umea jaio aurretik egingo diagu, eztuk?». «Bai sobera ere!» erantzun eban. Umea jaioa zen eta oinez ikastera zihoan, esan neutsonean: «Hi! Umea ezkondu aurretik egingo diagu, eztuk?». Artean ahotsera itzulia eta kantuan hasia nintzen eta diskoan neuk be kantatu behar nebala ekiten eustan, baina egindako planari zentzun osoa ikusten neutson eta ez neukan konplikazino gehiagotan sartzeko gogorik.

IZ Disketxean atara genduen, neure gogoaren guztiz kontra. Esaten neutson: «Lehen ere badiat nahiko eskarmentu etxe horrekin eta ez al zagok beste moduren bat?». Anje Duhaldek baebazen han disko batzuk eginak eta, estudio-lan guztiak egitekoa bera zen ezkero, amore emon neban, gero ederto damutu bajakon be. Grabazinoagaz batera 300.000 pezeta (bakotxak 150.000) jasoteko tratua egin genduen. Ez menbreterik ez inongo sinadura barik, sukalde-paper soila izan zeitekeen inpreso batean, Anje Duhaldek, eta haren bitartez nik, agiri hauxe jaso genduen:



FECHA: 21-12-90
CANTIDAD:
CONCEPTO: Resto de Grabación IZ-342-Anje Duhalde / X. Amuriza. Royaltis.
P.V.P. UNIDAD:
TOTAL: 300.000.

Horixe izan da hartu dogun lehen eta azken informazino bakarra. Aurrez berba egin genduen 300.000 pezetako kopuru erdibanatzekoaz beste zehaztasunik bapez. Harrezkero urte piloa igaro da. Eta holantxe beste lan guztietan. Ez dakigu zordun ala hartzedun garen. Beharbada mesede handi bat egin dausku, lan ruinosoak argitaratuz, beharbada estafatu egin gaitu, saltze minimo bat lortu badau. Ez dago ezer jakiterik. Egin geinkeen bakarra da pirata-kanta martxoso bat atara, jentea lapur-dantzan asaska daiten. Ez dot uste gozamen hori bete barik hilko nazenik.

Diskoa kaleratutakoan, herririk herri kantatzen hasi ginen, diskoko bertso sortak, Duhalderen beste kanta batzuk, bat-bateko bertsoak, alkarrizketak eta lekuan lekuko formula espontaneoak tartekatuz. Esaterako, harek fondoko gitarra ritmo bat zeroala, nik ipuin antzeko bat kontatuko, errezitatuko edo bertsotan kantatuko neban. Egitura finko samar baten barruan aldaera txiki baina bistosoak sartzeko modu asko dago, aurretik zerbait adostu ezkero. Hortxe zetzan gure ahulgune nagusia, ez genduela gauzak taxuz lantzeko eta entseiatzeko astirik hartzen. Gehienean jaialdi egunerako bertarako izten genduen eta horrek, hagaitik edo horregaitik, ehuneko larogeian huts egiten dau, beti gertatzen baita zeozer. Bata berandu iritsi dela, bestea nekatuta dagoela, ekipoa falta, aretoa hartua, atezainik ez, edozein ezuste nahikoa da, jaialdi egunean ezer taxuzkorik egin ezin izateko. Baina garbi dago, zein ezuste konkretu asmatzerik ez badago be, honein existentzia guztiz jakina dela. Beraz, ezustea ez da ezeren atxaki, gertatuko dela segurra denean.

Diskoa arrakastatsua eta ondo asmatua izan zen arren, aurrez alkarlan gehiago izan bagendu, gauza batzuk lortuago urtengo eben. Bertsolariak kantariari eta musikariari bere sorten esanahia ondo ulertuazo behar dautso, bai berben eta ahapaldien esanahi materiala, bai intentzinoa eta giro orokorraren norabidea: ironia, satira, sentimena, umorea, samurtasuna, indarra, dramatismoa, surrealismoa... edo zenbait erregistroren konbinapena. Testua ondo ulertutakoan, musikari-kantariak haren espresinoa asmatzen saiatu behar dau. Disko honetan bertsolariaren eta musikariaren arteko sintoniarik ezaren kasu nabaria «Hilkutxan ere kantari» izeneko sorta da. Lehenengo ahapaldiak dino:

*Tristerik nintzen tristerik*
*ia hiltzea usterik*
*pentsatzen nuen: «Ez ote dago*
*gogo hau pizterik?».*
*Ez pizterik ez eusterik*
*arimaraino husturik*
*Kantuan hasi nintzen gaizoa*
*Zer egin besterik?*

Ahapaldi honek poema nahibagetu bat iragar daike, ondorengo garapenaz jabetu ezik, eta uste dot Anje Duhaldek hasiera honexek despistaturik jarri eutsola hain doinu tristakorra. Ahapaldia ez da, ostera, ahalik kontrasterik jausieneko abiakera bat besterik, ondoren garatzen den kantuaren dohai altxarazlea nabarmentzeko. Arimaren husturatik kantuaren gaineztasun euforikora igoten da, «hilkutxan ere kantari» amaitzeraino. Nire gogoan kantuaren indarra adierazo gura eban sorta hau guztiz bitala, ia epikoa zen eta doinua araberako sentitzen neban. Aurrez ez genduen behar beste berba egin eta piezaren airea nire asmotik urrun gelditu zen. Beste sortetan be aurre-hizketa gehiagok testuekiko fideltasun handiagoa ekarriko eban.

Halan be, garbi itzi nahi dot lanagaz, oro har, pozik geratu nintzela eta arrakasta polita euki ebala, herririk herri kantatzean, oso agiria zenez. Gure jaialdiak aldi berean sinpleak eta indartsuak ziren. Kantatuko genduzen bertso paperak entzuleen artean banantzen ziren eta, azalpen llabur baten ondoren, bakotxak oso ondo jarraitzen eban guztia, baita kantatu be. Anjeren repertorioko beste zenbait kantagaz nahastean, eta bat bateko bertso, kopla, errezitapen eta gogoratzen jakuzen nobedadeak tartean zirela, ordu eta erdi igarri barik joaten zen. Urte batzutan Euskal Herriko baztar ugari jo eban ibilera ha nire bertsolaritzako atalik maiteenetakotzat gogoratuko dot.



## BERTSOLARITZAREN MENPEKO

1994 inguruan gizonari (eta andreari be bai segurrenik) gizarte honetan gerta daitekion egoera larrienetako bat iritsi jatan: behar barik geratzea. Estudio baterako urteetan egiten niharduen egokitze lanak gainbehera egin eban eta etorkizun baltza usnatzen neban. Hatan, proiektu baterako proposamena etorri jatan, egokitze lana itxi neban («Bai, bai! Itxi billur barik!» esan eusten) eta urtebete, neure gogoko lanak eginez, (eta kobratuz!), bitsetan pasatu neban, hain zorte sinesgatxean aluzinaturik. Orduantxe egin nebazen «Bizkaiko Bertsogintza -I- Izendunak» eta «Bizkaiko Bertsogintza -II- Izengabeak» eta beste zenbait lan. Urtebeteren buruan espejismoa birrindu zen eta sasian geratu nintzen, mihin bako arran.

—Hi behar barik? —harritzen ziren zerbait entzuten ebenak—. Hara-hona lotu barik habil-de!

—Ibilli tte biherra bai, baia kobretakoa be bi'jjoat.

Nire bizimodua bertsolaritzatik eskegita gelditu zen eta orduantxe onartu behar izan neban bertsoa nire «bizipide» zela. Bizipide urria, ostera, orduantxe ohartu bainintzen nire plaza

ordainduak (besteek bardin jarraitzen eben) asko jatsi zirela eta jasten ari. Bizimodurik erdia edo gehiago beti atara izan dot bertsolaritzatik, baina ez beste lanik ez neukalako edo ezin nebalako, neuk halakoxe konbinapena aukeratu nebalako baino, eta halan, bertsolaritzari esker, denpora asko libratu ahal izan dot, beste hamaika asmo burutzeko, gehienak ruinosoak, egun osoko lantegi finkoan ezinezko izango zirenak. Ez neban pentsatuko berrogeta hamairu urtegaz bertso saio triste batzuren mende geratuko nintzenik. Adin horretan, inongo titulu barik (ezer ez eukitearren, ez daukat EGArik be) eta nire izenagaz, ez zegoen ate joka hasteko panorama gozoa. «Edozer, gixon! Hik laster topeuk'ok zozer» esaten eusten. Inork ez eban sinesten egoera haretan aurki neintekeenik eta urte batzuk lehenago neuk be horixe joko neban azken inposibletzat, baina aurrera zihoazen hilek ez zekarden ezer, zuloa handitzea besterik.

Emakume mistiko batek esana, «apaltasuna egia da», gaztetan sakon atxikita geratu jatan, ezin bainintzen benetan jabetu faltsukerian edo anikilazinoan oinarritzen zela sentitzen neban bertute haretaz, baina, egia bera be existentzia erlatiboa zen ezkero, ez nenkien neure adimena non kokatu. Ahalaren apaltasuna pose edergarri bat baino ez zela usnaturik, ezinaren apaltasuna geratzen zen, baina ezinari ez dagoko kalifikazinorik eta gitxiago jarrerarik, bera baita izate baten definizino totala. Ahalaren eta ezinaren artean beharrizana jo neban, bertan aurkitzen zarenean bakarrik aurkitzen dozuna. «Apaltasuna beharrizana don! —hots egin neutson emakume mistikoari —. Hau ez don harrotasuna kontrakotik emendatzeko asmatu eben jarrera intelektual bat. Hau benetako apaltasuna don, merituaren ilusinorik permititzen ez dauena». Beharrizanaren larritasuna, nik bizitzan sumatu besterik egin ez dodana, (zer ete da bertan jaio eta hilten direnena?), ez dago dakienari azaldu beharrik eta ez dakienari alperrik da ekitea. Beraz, buka dagidan esanez, denpora nahi baino luzeagora, konponbide antzeko bat aurkitu genduela, bizimodua aldrebestu bajakun be.

Bizitzaren belarrondoko ustebage honek bertsolaritzagazko beste erlazino bat ekarri eustan. Lehen neu nintzen hari ustez zeozer eskeintzen neutsona, ze, erdi bat beragandik bizi banintzen be, ez zen preminagaitik, aukeragaitik baino. Orain, ostera, bere menpeko, ia eskeko, aurkitzen nintzen, baina emon ahal eustana asko gitxitu zenean. Gaidun saioetan ez nenbilen, neure erabagiz, eta beharrizanagaitik itzultzeari apalmen handiegia neritxon, nahizta bera izan arrazoirik nobleena. Badakit inoren aurrerako, benetako arrazoiak ezkutaturik, diskurtso bistosoa eta interesgarria biribildu neikeena, baina neure buruagazko be behar neban derrigorraz haragoko arrazoi libreago bat. Geroago itzuli nintzen saio mota honeitara, neure aro independentea amaitutzat emonik. Zelanbaiteko guleria betea neban, ezelako atxikimenik ez neban lortu eta lortzeko itxaropenik gitxiago. Beraz, lautar bakartiaren ahaleginari ez neutson beste zentzunik aurkitzen, geroz bakarrago geratzea baino. Hataz damutzeko motiborik ez izanaz ganera, bertsolari bizitzako arorik gozatsuena ekarri eustan erabagia batez be neure buruagaitik hartu neban, baina ezin dot ukatu bide batezko eragin kolateralak be itxaroten nebazela. Honetan guztiz erratu nintzen, nire jite ilusoari sarritan gertatu jakonez. Periferiatik oso gatxa da, ezinezkoa ez esatearren, erdirantz influitzea. Ohiko saioetara itzuli nintzen eta panorama oso berdintsu aurkitu neban. Gai eta gai jartze kontuan ezer gitxi aurreratu da, akatsen eta txorraden bariazinoan ez bada. Gai egokien kasuan be, saio gaidunen eredua ezer gitxi aldatu da Alfonso Irigoienek 1958an (harrezkero mende erdi igaro da) asmatutako (txapelketarako asmatua ganera) egituratik.

Itzuli nintzen, baina oso era mugatuan. Nire presentzia jaialdi handietan guztiz marjinala da eta librekoetan be joera bera nagusitu da. Zerbitzuzko edo kausa ezbardinen aldeko ibilerak kendu ezkero, bertsogintza soileko deiak bakanduz doaz oso. Lehenago hainbat bider iristen nintzen eskualdeetan, orain albo-

tik pasatu beharraren tristura puntua («zenbat urte et'ok hemen ixen enazena?») gainditu daikezu, baina ez ukatu. Sentipen horrek batez be Bizkaian joten nau, non, euskalkiagaitik edo, gomuta etxekoiagoa daukadan, eta, bertsoaz bestelako hara-honetan Bizkaian askoz gehiago ibilten nazen ezkero, gatxago egiten jat lehengo eta oraingo plazen konparazinoa ekiditea, hain gomuta finkatuak eta indartsuak barritzen baitira. Horrek bizi guztian erdibitu nauen dilemaren aurrez jarri nau barriro, nahizta oraingoan zalantza terminalak izan daitekezen. «Jarraittu eingo jjoat ala heldu nok tren honeri joaten ixteko geltokire?». Ez naz erantzuteko gauza.

Bertsolaritzan norbere faltarik eza sentitzea tamal txikia da beste bizi-sentipen orokor baten aldean. Bizipidearen kinka larrian aurkitzen ez banaz, ez dot uste bertsoaren «monorik» geratuko jatanik. Gehiago dardaratzen nau sentitzeak bizitza guztia ha zelan konpondu pentsaketan daroadan munduak ez dauela nire faltarik igarriko. Lora batzuk nire gomutaren ganean zimelduko dira, benetako malko batzuk bizirautera obligatu gura izango nabe, nire bertso baten («ni hiltzen naizen gauean behintzat / eizue lo lasai») aginduaz kontra, omenaldiak egingo jataz, baina horrek ez dau ikutzen bape faltarik egingo ez dodalako sentimenturik. Ez nau izorratzen milaka mende ni barik lasai egin ebari Anbotok beste hainbestetan bardin iraun dagian, baina goibeltzen nau, ni pasatzen ikusi eta gero, berak ezeren faltarik ez igarteak, nahizta zorte itzela daukadan, ni pasatzean, Anboto aurrean gertatu delako, hutsik barik. Ez nau izorratzen nire gomutak inor ez dagiala tristetu benetan opa dautsodan gizateriak ni barik bardin dohatsu edo dohakabe jarraitzeak, ezer falta ez balitz lez. Orduan zerk izorratzen nau?

Beharbada nire faltarik igarriko ez dauen mundu bat konpontzen saiatu beharraren patua da izorratzen nauena, batez be alperreko patua ez ete den susmatzen dodanean, baina beste suposamena be apenas den baikorrago, ze, mundua konponduta itzi nebala jorik, are gitxiago baileuke nire faltarik. Kontzientziaren



bikoxte imajinagarri batez, (imajinatzen baitot), neuk neure faltaz ohartzeko ahalbide bat ikusiko baneu, beharbada bertsotatik be nasaiago libratuko nintzateke, baina neuk be ezingo badot neure buruaren faltarik hartu, zer kontsolamen geratzen jat? Ez orduan, oraintxe baino, izangoaren pentsakizunek, baikorrek nahiz ezkorrek, banazela sentitzen dodan unea izorratzeko besterik ez dabe balio-ta. Nork askatuko nau presentetik, denporari joaten izteak beti bertan izten banau? Beharbada zorotasuna dateke askapen minimoki kontzientea, (partaidetza kosmikorik miragarriena ez jat interesetan bertsino inkontzientean), baina, norbere esku ez egoteaz ganera, zaila da zoratzen ausartzea.

Bertsolaritzaren ilunabar sentsazinora itzulita, egoera honek, zeharki eta gogoeta defentsibo lez beharbada, lasaitasun pertsonal ikaragarria ekarri daust. Oraintsu arte, beti nenbilen zerbait pentsatzen, planteatzen, proposatzen, beti nerabilen zerbait egin beharrekoa buruan, besteentzat be ilusinogarri izan zeitekeela uste nebana. Esan barik doa buruerarik gehienak porrotean amaitzen zirela, edo ez zirela neuk nahi besteko indarrez garatzen. Orain besteakaz burutu beharreko ekimen posibleei eskerronez lagata nago. Zerbait eskatzen bajat, baietz edo ezetz erantzungo dot eta, baietza bada, ahalik ondoen eta pozen kunplituko dot, baina neure gogoa inplikatu barik. Ez naz ekimen barrietan engaiatuko, bakarrean egitekoak ez badira. Jarrera hau, alperreko zaputzetatik libratzaile izanez ganera, ez dakit objektiboki emankorrago ez den, eskea dagoen tokian ez baitago porrotik. Alderantziz, ostera, ideiarik ustez bikainenak arbolan igartuko dira, hareikanako apetarik ez badago. Denpora lar joan jat konturatzen inogaz tiraka edo bultzaka ibilteko asmoek ez dabela merezi (ganera gogaikarri fama irabazi!), neuk neutara hainbeste gauza egin ahal izanda.

# 11. Azken aldiko lan batzuk

## Bizkaiko kopla zaharrak

«Neuk neutara egitekoak» esan dot. Bakar ekimenetan asmoen ehuneko ehuna edo gehiago lortzea eskuan dot. Neure buruaren ahalak eta mugak ondo ezaguturik, helburu bat markatzen badot, lortzekoa izango da, eta lor badaiket, lortu egingo dut, ez bainago inork betetzekoaren gorabeheran. Lan honeitako bat Bizkaiko kopla zaharren antologia da. «Bizkaiko Bertsogintza -I- Izengabeak» liburuan pare bat mila kopla inguru batu nebazen. Liburuan egotea garrantzitsua da, toki berean eta jakinean jasota dagozen aldetik. Baina horrek ezer gitxi balio dau, materialaren gozamena euskaldunen belarrira helarazo ezik. Horixe da berrehunda berrogeita hamar bat aleko antologian egin dodana. Kopla erreskada luzeak musikalki bape praktikoak ez diren ezkero, zeozergaitik politenak edo esanguratsuenak iruditu jatazenak hogeta zazpi sortatan banandu nebazen, oso erizpide libreen arabera, (koloreak, esaterako), Bizkaiko koplaritza, ugariena den dantzakoa batik-bat, ez baita argumentu logikoen inguruan garatzen. Lan guztiau (bi mila koplatatik lehenengo hautu zabal bat egin, hemendik multzo definitiboa finkatu, hainbat lore polit alboan itzita, gero sortaka banandu eta sortak doinuen eta ezaugarrien arabera eratu) uste baino zeregin luzeagoa izan da, baina bai atsegingarria! Norberak txikitatik maitatu eta gero osoan deskubritu dauen materiala eskuartean lantzeak gozamen atabikoak eta futuribleak bateratzen ditu.

Materiala prestatzea hain gozagarri bada, zer esan gero jente aurrean kantatzeaz eta halako xarma sortzen dauela ikusteaz? Koplaritza hau helarazoteko hiru formatu nagusi bereizten dodaz. Erarik sin-

pleena neuk bakarrik kantatzea da, egiten hasita nagoena. Musika barik galtzen dauena, materialaren ezagutzan irabazten dau, koplak argi eta ezeren distrakzino barik entzuten baitira. Entzulearen irudimenak jarten dautso laguntza musikala. Emonaldi hau barrupe bilduetan bakarrik gauzatzekoa da, tokien eta jente motaren arabera, beti be entzuleria mugatu samarren aurrean. Norberak bakarrik egin daikeen lanak ez dakar, baldin badakar, arrakastarik banandu beharrik, ez inorekin tirabirarik, ez hasarratu beharrik, zeozerk oker urten badau. Bigarren formatoa musikaduna da, soinu-panderoak gitxienez. Era honek jaialdi oso baten ezaugarriak leukez, baina beti be glosazko berba batzuk tartekatuz, materiala ulergarriago eta ederrago hel daiten. Azkenik hirugarren formatoak disko ondo egin bat izan behar dau, non koplaritzako mundu testuala eta anbientala ahalik egokien eta xarmagarrien musikaturik entzunazoko den. Prozesu guztionek ez dauka suzesiboa izan beharrik. Nahizta hiru formatoak alkarren osakuntza progresiboa izan, gero hirurak batera gerta daitekez. Behin kantatzen dot bakarrik, behin musikariakaz, eta bueltan etxerantz kaseta entzuten nator autoan. Tapia eta Leturiagaz lanean hasita nago.

Musikariakazko jaialdia konpartitua da eta arriskuak gehitu egiten dira, baina, hartuta nagoen eskarmentuakaz eta daukadazen lagunakaz, nahiko arrisku kontrolatuak dira. Diskoan, barriz, ia ehuneko ehunean garantiza daiteke lana ondo egitea, behar den plangintza minimo bat aplikatzen bada. Gozamen segurreko terrenoan nabil, beraz. Behin baino gehiagotan ernegatu dot neure buruaz, pentsatuz ezen, inork jaramonik ez egiteko asmoetan kontsumitu beharrean, zergaitik ez nazen honelako lanetan gehiago zentratu. Zorionez oraindik ez nabil berandu.

## Bizkaiko bertso zaharrak

Bizkaiko kopla zaharren antzera, bertsoakaz be beste antologia bat osotua daukat. Koplaritzak «Bizkaiko bertsogintza -I- Izengabeak» liburuaren erdia hartzen dau. Beste erdia bertsoak dira. Honeitako selekzino bategaz eta «Bizkaiko bertsogintza -II- Izendunak» liburuko bertso sortarik interesgarrienakaz bilduma bat hautatua eta prestatua daukat, koplaritzakoaren paretsu, eskeintza bitxia eta xarmanta gertatuko dena. Lan honen musikagintzari buruz, Oskorri taldeagaz berba egin neban, ideia gustatu jaken eta eurokaz burutuko dot segurrenik.



## Xalbador, bat-bateko mirakulua

Xalbador bertsolariak, bertso jarrietan parebakoa izanik, bat-batean harritu nau gehien. Buruz dakiguna, nozean behin errepasatu ezik, ahaztuz joaten da. Estudiante sasoian eta gero kartzelaldian nire buruan ziren ehundaka bertsoak, gaur kantatzen hasten banaz, nekez gogoratuko ditut ganoraz. Errepaso txiki bat emonda, oso errez itzultzen dira, baina honela, beste barik hasita, urte batzutan kantatu bakoak badira, gero eta lanbroago etorri ohi jataz memoriara, nahizta gehienak bertso jarriak izan. Xalbadorrenak, ostera, askoz nekezago ahazten jatazela konturatu naz. Izan be, haren bat-bateko bertsoak, ez bat edo bi, dozenaka baino, harrigarriak dira.

Inoz burutik pasatua jatan nenkizen Xalbadorren bat-bateko bertsoakaz emonaldi oso bat burutu zeitekeela. «Ez al litzateke gauza ederra?» pentsetan neban gero. Haren holako bertsoakaz ordu t'erditik pare bat ordura betetzeko moduko antologia bat osotzea ez da lan gatxa. Behin, 1998ko zezeilaren hamalauan, Euskal Herriko Bertsozale Elkartearen urteko biltzar osteko bazkarian, Pausuko muga ondoko «Xaia» jatetxean, Daniel Landarten alboan gertatu nintzen eta, beste zenbait konturen artean, Xalbadorren bat-bateko bertso antologiaren ideia hauxe aitatu neutson. Gustatu egin jakon. «Joño! —pentsatu neban —. Ea hementxe erdi olgetan hasi eta benetako asmo batek urte-

ten dauen!». Ordurako asmo barrien proposamenari erria emonda nengoen eta ez neban barriro ilusinoen mastan gora hasi gura, baina Landartek esan eustan berba egingo ebala bera langile den Ustaritzeko Euskal Kultur Erakundeko zuzendariagaz eta halantxe itzuli nintzen etxera, plan posible eta laketgarri baten egiantzera larregi ez sineskortzen ahaleginduz. Laster jarri eusten hitzeguna, egitasmoaren ildo nagusiak azaldu nengizen. Itsasuko jatetxe xarmant batean bazkaltzeko jesarri ginen eta asmoa azaltzen hasiz batera onartu eben eta lanaren kostua zenbat izango zen galdetu. «Joño! —harritu nintzen —. Bai tratu erreza eta abantailosa! Iparraldean gertatu behar hauxe be!». Hona gero, erakundearen dokumentazinorako eskatu eusten egitasmo agiritzat, bialdu neban idazkia:

*Jaun adiskideak:*

*Erakunde goragarri horren eskariz, XALBADOR, BAT-BATEKO MIRAKULUA izeneko proiektua aurkeztu nahi nuke. Hori edo horren antzeko izenburua (hori zehaztuko genuke) leramakeen asmo honen funtsa hauxe litzateke:*

*1) Xalbador bertsolaria bat-bateko bertsogintzaren mirakulutzat jotzen dut. Haren bertso jarriak miresgarriak izanik eta hori mundu guztiak aitortzen duelarik, ni batez ere Xalbadorren inprobisazioak harritzen nau eta harridura horixe da transmititzea erdietsi nahi nukeena.*

*2) Bertsolaritzak Euskal Herrian daukan indarrarekin eta azken urteetan bizi izan dituen aldakuntzekin, guztiz beharrezko eta aberasgarri iruditzen zait, baita gozagarri ere, Xalbador bezalako jenioen altxorra ezagutaraztea. Ez dea, bada, ezagutzen? Ez da ezagutzen! Gauza bat da haren ale solte batzuen berri norbaitzuek jakitea eta beste bat haren antologia bat entzulego zabalagoari gozaraztea. Eta bidenabar Xalbadorren artea belaunaldi berrientzat ere erreferentzia bilakatzeko modu bat asmatzea.*

*3) Jo dugu asmoaren hitz mugatzaile bat: ANTOLOGIA. Helburua ez litzateke hainbeste haren bat-bateko bertsoen bilduma handi bat liburu gisan eskaintzea. Gutxi-asko, Xalbadorren bertsoak lehendik ere badaude liburuetan jasoak. Jasota egotea garrantzitsua da, noski, baina HELARAZI egin behar dira. Horretarako ordu eta erditik pare bat ordura bitarteko emanaldi batean eskaintzeko moduko antologia prestatu behar da. Hori da nik egingo dudana. Laurogei bat bertsotako selekzio bat burutu, zeintzuetarik den-denak ez diren Xalbadorrenak izango, binakako saioetan beste bertsolari lagunenak ere eman beharko baitira, Xalbadorrenak beren kontestuan entzun daitezen. Antologia hau nik neure erara ordenatuko dut, antzerki edo entzunkizun oso bat bailitzan, horretarako gidoi lotzaile bat idatziko dudalarik.*



*4) Antologia ona eta garantiazkoa burutzeko, biltze lan zabal bat egin behar da, handik gero onenak hautatzeko. Lan hori liburuetatik eta lekuko zuzenen bitartez egingo dut. Bistan da bilketa zabal horren lehen fasean gero antologian sartuko diren baino askoz bertso gehiago jasoko direla. Demagun lehen hautatze horretan hirurehun bat bertso daudela. Zer egingo dugu gero, bigarren hautatze zorrotzagoan, laurogei bat bertsotako antologiatik at gelditu diren berrehun eta hogei bertso soberazko horiekin? Hemen ez dago deus soberazkorik. Hauek emanaldiarekin batera, edo ikusiko dugu nola, liburuska batean eskain daitezke, antologia zabalago gisan, zeren suposatzen baita hauek ere kalitate baten kariaz hautatuak izan direla lehen fasean.*

*5) Nola eman delako antologia? Materiala eskuan daukagunean zehaztuko dugu hori, baina bi modu oraintxetik argi daude. Bata eta sinpleena da neuk bakarrik (edo beste batek) egitea dena, bertsoak kantatuz eta gidoia eramanez. Bestea eta landu beharrekoa litzateke entzun-ikuskizun gisan prestaturik ematea. Hemen posibilitate handiak leudeke, materiala eta gidoia ikusi eta gero, beste artista batzuen talentua garatzeko.*

*6) Beraz, eta amaitzeko, nik bilketa zabal samar bat egingo dut. Hortik hautatu eta hura landuko dut, emanaldi batera mugatzeko moduan. Zuen Euskal Kultur Erakundeari bi lanak entregatu-*

*ko dizkiot, bai emanaldiko antologia, baita lehen biltze zabaleko emaitza ere.*

*Asmo pozgarri eta gozagarri hau onez eta laster burutuko dugun itxaropenean, har ezazue besarkada lagunkoi bat.*

Arestian aitatu bilera egunean Baigorriko «Basaizea» alkarteko bertso afarian partaide izan nintzen. Bueltan, etxeko sukaldean, ez nintzen berehala oheratuko, zigarretak erreez eta nekarren pozari federik ezin emonez. Hain gogoko lana eta ordaindua! Egunsentia leihoa kilikatzen hasi zenean, gogo handi barik erabagi neban: «Noan ohera, legea egiteko baino ez bada be». Bertsolaritzari zor dautsodan poz handietako bat abian zen eta dagoeneko burutua da. Iparraldean saio batzuk egin dodaz eta Hegoaldean be itxaroten dot eskaria izango dela.

## HIZTEGI ERRIMATUA, HITZAREN KIROL NAZIONALA

Teoria mailan bertsolaritzari egin dautsodan ekarpenik handiena izenburu bi honeitan dagoela uste dot: «Hitzaren kirol naziona la» eta «Hiztegi errimatua». Egin diren edizino bietan biak batera argitaratu badira be, oso liburu ezbardinak dira, nahizta alkarren osogarri. «Hitzaren kirol nazionala»n lehenengo zatia bertsolaritzari buruzko gogoeta gitxi-asko diskutigarriek osotzen dabe. Bigarrena, ostera, teknikari edo bertsoaren formari buruzkoa, guztiz zehatza eta eztabaida gitxi onartzen dauena da, edukiari buruz behintzat. Beste kontu bat da azaltzeko modua, horretan metodo asko egon daiteke-ta. Bertan doinua, neurria eta errima aztertzen dira, neurria eta errima batez be, euron erraiak sistematzen eta bistaratzen saiatzen nazelarik, eta, urteak igarota be, uste dot helburua oso neurri handian eta argian lortu nebala. Neurriaren giltza edo sekretu nagusiak agirian geratzen dira, baita erabil daitekezen baliabideen (berbak gehien batez) zerrendak be. Alde horretatik neurriaren «hiztegia», zelanbait esanda, «Hitzaren kirol nazionala»-n dator, teoriagaz batera.



Errimagaz gauza bera egin zeitekeen, teoriaren ondoren hiztegia jarririk, baina, osotasun guztiz zehatza eta ezbardina (baita luzea be) hornitzen ebala pentsaturik, aparteko liburukian argitaratzea erabagi neban. Segurrenik berau izango da bertsolari eta bertsolarigaientzat materialik praktikoena eta garrantzitsuena. «Hiztegi errimatua»-k, euskerak errimatzeko daukazen baliabideen barri zehatza emonaz ganera, ideia barriak edo era barrian esateko ateka amaibakoak zabaltzen ditu, azken batez esan behar den guztia berben ganean baitoa, eta bertsoan, ezelako duda barik, berbarik garrantzitsuenak oinak edo errimatzen daben berbak dira. «Nahikoa, Jainkoa, begikoa, betikoa» ala «zikloa, lexikoa, arketipoa, malefikoa» oinakaz osotu, bertsoak oso kolore diferentea eukiko dau, nahizta ideia bardinak esan. Eta segurrenik oin honeik ideiak be ezbardinak ekarriko dabez, berba bakotxa gure buruetan bere faunari edo ideia moltzoari asoziaturik dagota. Hiztegi errimatua, beraz, esatekoari errima mailan urtenbide teknikoa emonaz ganera, ideia barrien eremua zabaltzeko abiagune oso zehatza da.

Susmoa daukat ondino ez direla asko, hiztegi errimatuari etekina ataraten dakienak, bertso eskoletan eta gazteakaz dodazen harremonetan obserbatu dodanez. Askok ez dautsoe hiztegi errimatuari heldu be egin. Etxean dauke, baina ez dabe ezagutzen, edo ez dakie beragaz zer egin. «Ni gogaitu egiten naz berba zerrendak irakurten». Edo: «Bai! Inoz ekiten dautsot berba zerrendak egiten, hiztegi errimatuan egiten den antzera, baina ez dakit ezetako balio daben». Honelako iruzkin bitxiak, zeozertan ahalegindu direnen artean. Gehienek, halan be, lepoak altzetan dabez, esaten lez ze:

—Pentsatu ere ez dut egin. Guk ez dugu hiztegi errimaturik lantzen.

—Orduan norentzat da «Hiztegi errimatua», gazteok eta

karreradunok erabiltzen ez badakizue?

—Ez dakit.

Gogoan dot zelan, 1978. urte inguruan, Loiolan bertsolarien jardunaldi batzuk egin genduzen, hitzaldi gisan antolatuak, frankismotik demokraziara pasatzeak ekar zeikezen zirkunstantzia ezbardinen aurrean zenbait gogoeta eginez. Badakit Abel Muniategik informazino politikoari buruzko hitzaldi bat edo batzuk emon ebazela. Ez naz zehatz gogoratzen zenbat hitzaldi eta hizlari izan ziren, ezta egun bakarra ala gehiago izan zen be. Dakidana da bertsolari gehienak batu zirela, garai beroak eta danen ardurakoak baitziren. Nik hiztegi errimatua izango zena aurkeztu eta azaldu neban, materiala orri fotokopiatuetan emonez. Ondino ez zeukan liburu formarik, baina gehienbat haxe izango zen gero argitaratuko zena. Artean «berezkoaren» ideia hain indarrean zegoela, berba zerrenda errimatuak paperean emotea nobedade heretiko samarra gertatu zen. Batzuk esango eusten:

—Hauek denak oso ondo egongo dituk, baina gure buruetan sartzeko, berandu samar dela uste diat. Gu beste modu batera ohituta gaudek.

Urteak joan eta gero, paperetara eta liburuetara ohituta dagozen gazteak eta karreradunak be, neurri handi batean, «beste modu batera ohituta» jarraitzen dabela uste dot errima kontuan. «Hiztegi errimatua» ez da irakurteko, ez imitazinoz zerrendak egiteko, ez izan daitekezen hamaika eratako batean aspertzeko. «Hiztegi errimatua» errimaren entziklopedia bat lakoa da, non bakotxak, haren egitura ondo ulertu ondoren, bere errima pertsonala segurtatzen, zabaltzen, barritzen, errima mota bakotxaren mugak eta ahalbideak bereizten, eta abar, ikas daikeen. Horretarako ezinbestekoa da erabilten jakitea, euskal errimak, zer euki leikeen barik, praktikan zer daukan ondo jabetu ondoren, norberak gura dauena zelan eta non aurkitu eta zelan barrituz joan



asmatu ahal izateko. «Hiztegi errimatua» oraindio gehienen buruetan deskubritzeke ez ete dagoen nago.

Liburua lehenengo edizinotik (1981) bigarrenera (1997) nahikoa aldatu zen. Lehenengoaren oinarria Azkueren hiztegia izan zen eta lan gehiena espetxean egin neban. Han, denporasobra izorranteaz baliaturik, Azkueren hiztegia atzekoz aurrera jarri genduen. Gero handik selekzino bat eginez («garri» atzizkian agertu ziren ehundaka hitzak, esaterako, dozena batera murriztu behar ziren) eta hitz bakotxa bere sailean eta azpisailean jarriz joan nintzen. Azkueren hiztegiak muga handiak daukaz, ostera, gaurko hizkuntzarako. Lehen edizinorako hainbat berba neurez erantsi neban arren, funtsean Azkue zen iturri ia osoa. Bigarren edizinoan egiturari ez neutson ikuturik egin, honek baliodun jarraitzen baitau, baina berba zerrendetan hornitze nabaria eta ugaria egin neban, «Elhuyar Hiztegi Entziklopedikoa» oinarritzat harturik. Ondorioz, errima hiztegi modernoa geratu dela esan geinke eta nik behintzat ez dot uste beste barrikuntzarik egingo dautsodanik.

## ZU ERE BERTSOLARI

1982an Basauriko espetxean egin neban egotaldiak «Zu ere bertsolari» ekarri eban. Ez zen guztiz denpora galdua izan, Ameriketarako bidaia bat izorratu baeuskun be. Dana egina geunkan, Josu Zabala soinulari hartuta, egun mordo batez Estatu Batuetako euskaldunen artean kantari ibilteko. Bertsolari laguna Lopategi zen. Ni falta izatean, Josu Zabala be airean geratzen zen eta beste bertsolari bat, Imanol Lazkano, bialduta konpondu zen auzia. Bi bider izan dot Ameriketarako bidaia egina eta batean pasaporterik emon ez eustelako, bestean preso nengoelako, hain barik geratu nintzen. Fama mota baten abantailak dira honeik.

Errege-erreginak Gernikako juntetxera etorri zirenean,

HBko hautetsi talde batek, Juan Carlos erregea berbetan hasi zenean, *Eusko Gudariak* kantatatzeari ekin geuntson behin eta barriro, harik eta indarrez eta joka kanporatu ginduezen arte. Ekintza haregaitik auziperaturik, fidantza bana ezarri euskuen, ez ordaintzea erabagi genduena, eta hautetsiak espetxeratzen hasi ziren. Hatan, inork itxaroten ez eban ezustea emon eban Euskadiko Ezkerrak, HBko hautetsi presoen fidantzak ordainduz, interesatuei ezer galdetu barik. Preso zegozenak kaleratu ebezen, baina hiru falta ginen atxilotzeko, Jon Idigoras, Jokin Gorostidi eta ni, ez baiteben operazinoa batera egin.

Barrukoek urtendakoan, prentsaurreko bat emon genduen, non, HBren balorapenaz ganera, nik adierazo neban, erderazko agerpen labur batean, ha «operación chorizo» izan zela, dirurik behar izan bagendu, hainbeste gure amamak be bazeukala, komunikabideetan agertzea maite baeben, «la manguera al hombro» bota eta txakurrak kortejatzen hastea zeukela, lehen gitxi baziren, «ahora no les va a parir ni la parienta», alkahueteria haregaitik Madrildik hartzen eben saria Toledon bezeroak bilatzen gasta zegiela, eta halako puntada batzuk, Euskadiko Ezkerraren ekimen «imajinatiboaren» araberakoak. Beren-beregiko gordintasun harek adierazo gura eban saldukeria hari beste berbakerarik ez zegokola. Aitatu hiruron fidantzarik ezin izan eben ordaindu, ondino atxilotzeko baikengozen. Hori gertatu zenean, gure fidantzarik ez ordaintzea erabagi eban Euskadiko Ezkerrak, aurreko txorizokeria nahikoa zela pentsaturik-edo, eta denporaldi bat preso egin behar izan genduen, Jokin Gorostidik Martutenen eta Jon Idigorasek eta nik Basaurin. Han gengozela, Rufino Iraolaren bertso sorta bat agertu zen **Punto y Hora** aldizkarian, nire deklarapenen aurka eta Euskadiko Ezkerraren alde. Ondorengo sorta hau ordainak dira, Basauriko espetxetik eginak.



1)

*Zaldibitik tiratu*
*didate mingaina*
*aproban jarri nahirik*
*nire tamaina.*
*Laurogeita bigarren*
*urteko ekaina*
*bertsotan iritsi zait*
*danbolin bikaina.*
*Dirudi arraina*
*saltatzen ur gaina*
*hona nik azaina*
*horrentzat ordaina*
*hainbesterik ez zuen*
*merezi baina.*

2)

*Euskadiko Ezkerra*
*kofradi berria*
*egin zigun pagantza*
*txiflagarria.*
*Agertu nuelako*
*neure errabia*
*Rufino egin dute*
*denen zitzarria.*
*Bota dit harria*
*bertsotan jarria*
*hau nire irria*
*gartzelan zorria*
*«arkakusoak» hartu*
*behar neurria.*

3)

*Esan nian txorizo*
*edota lukainka*
*badela zuen goiko*
*mailan hamaika.*
*Alkahuete lan hori ez nezakek maita*
*lotsatu beharrean ttunttunka harraika.*
*Jotzen didak gaita*
*jartzen nauk ja-jaika*
*ez nauk hire aita*
*isilazi nahita*
*ez diat aginduko*
*alperrik baita.*

4)

*Hara zuen Lertxundi*
*eta Markiegi*
*Judasen poltsarekin*
*saltsan igeri.*
*Gero arrazoitzeko*
*zenbat pellokeri!*
*Kontuak eskatzera*
*nola hator neri?*
*Euri nahiz ateri*
*kusoak ageri*
*memoritik eri*
*zaudeten hoieri*
*zeuen hitzez esanda*
*«hau duk gehiegi».*



5)

*Azaina hori, aizak*
*pikuko oilarra*
*kukurruku jotzeko*
*ez duk edarra.*
*Atzetik eman eta*
*hau duk hau adarra*
*hartzaileak barkamen*
*eskatu beharra.*
*Falta zen bakarra*
*martxa militarra*
*nork ez egin parra?*
*Nahi al duk pitarra?*
*Beste leku batean*
*jo zak gitarra.*

6)

*Teatro bitxi hura*
*ez al duk gomutan?*
*Txorizokeri baten*
*antza zedukan.*
*Ez zakiat bertsorik*
*nola jarri dukan*
*ni neu behintzat linboan*
*gordeko nindukan.*
*Amets hauxe ukan*
*diat zazpi gautan*
*loaren kulunkan*
*ikusi hindutan*
*«Txori bat berriketan*
*arbola puntan»*

7)

*Sinesten badik lana*
*fedegabe batek*
*hain barregarri nola*
*joka zitekek?*
*Zeuen lagunak ere*
*lotsaturik zeudek*
*borratzeko agindu*
*behar anitz jendek.*
*Hire bertso hoiek*
*entzunda zenbatek*
*beste hainbat karnet*
*jango ote ditek*
*hain propaganda txarra*
*egin baitiet.*

8)

*Denontzat ez duk heldu*
*zuen dote pixka*
*zer kakalana eta*
*bera erdizka.*
*Isildu beharrean*
*hator hizka-mizka*
*baina barkatzen diat*
*berritsua haiz-ta.*
*Ez berriro pista*
*hortatik irrista*
*atera duk txispa*
*juxtu duen zizpa*
*horrekin nola ito*
*gure tximista?*



9)

*Bost mila militante*
*ba ote zaudeten*
*Armintzan bazakitek*
*zenbat zareten.*
*Goizean animoso*
*etxetikan erten*
*ganbaran ere hainbat*
*kabitu ziteken.*
*Zientu pare baten*
*zifrak hor nonbaiten*
*gehiegi bada ken*
*gehiago ez zineten*
*zuen partez neroni*
*lotsa ematen.*

10)

*Muturra sartzen bada*
*ipurdian berdin*
*gero zikindu gabe*
*atera ezin.*
*Kolpe horrek ez zidak*
*eman hainbeste min*
*ni ez nauk haserretzen*
*txorroskiloekin.*
*Gernikan zer egin*
*ongi bagenekin*
*Errege-Erregin*
*ta beste arlekin*
*ezkerra zein de hemen*
*haiei galdegin.*

**11)**

*Hamaikagarrenean*
*agurtzen dut plaza*
*honela bukatzen da*
*gaurko jolasa.*
*Urlia batek jo dit*
*tobera demasa*
*beharbada nahi zuen*
*historira pasa.*
*Ez da hain erraza*
*baina badu traza*
*baldin bada gauza*
*egon bedi lasa*
*betiko bildu baitu*
*fama eskasa.*

*Gartzelan zorria:* Bertso jartzaileak bertso batean zinoan «gartzelaren ditxa zorria ta sitsa» dela.

*Arkakusoak:* Hain zuzen zaldibitarren goitizena, Rufino Iraola hangoa baita.

*Lertxundi eta Markiegi:* Fidantza ordainketan buru agertu zirenak, Euskadiko Ezkerraren izenean. Hau duk gehiegi: Euskadiko Ezkerraren slogan bat «hau gehiegi da» izan zen.

*Bost mila militante:* Bertso batean «bost mila militante ez gaituk kusoak» jartzen eban Rufino Iraolak. *Armintzan bazakitek:* Hain zuzen 1982ko ekainaren 6an, Rufinoren bertsoek argia ikusi eben aldi berean, Euskadiko Ezkerrak Lemoizen aurkako egun «imajinatibo» bat antolatu eban Armintzan. Hainbeste propagandaz eta baimen guztiakaz,berrehundik hirurehun bat lagunera bildu eben Euskal Herri guztitik. Hirurehundik behera ziur.

*Arlekin:* Pertsonaia komikoa.

Honeixek dira bertso jarrietan egin dodazen bederatzi



puntuko bakarrak, erantzunaren motibokoak neurri horretan baitzetozen.

Basauriko espetxealdi harexeri zor dautsot «Zu ere bertsolari» liburua egin izana. Banerabilen bertso eskoletarako oinarrizko metodo praktiko bat taxutzeko buruera, bestela be nonoz egingo nebana, baina espetxeko denpora aluak aurrea hartzeko balio izan eban. Alua dinot, espetxeko denporak, bere izaerazko luzetasunaz ganera, gehigarri gaiztoak daukazelako. Denpora luzea izan ez bazen be, nire espetxe urteen esperientzian bera izan zen gogorrena. Preso politiko entzutetsu samarrak izanik, erizaindegian sartu ginduezen, non gehienean, gaixoez ganera, espetxeko presorik arriskutsuenak batzen diren, lesino bat probokatu dabelako, hagaitik edo horregaitik besteakandik apartatu behar dabezelako, eta abar. Gau eta egun dozena batetik hogeira bitarteko moltzo bat alkarren ganean egon beharra oso gogor egiten jatan, batez be, maiz aldakorrak izanik, ezagutzeko eta konfiantza hartzeko denporarik emoten ez ebelako. Beti ari zen baten bat joaten edo etorten.

Bazen bat, analfabetoa bera, idazten hasten nintzen guztian «¿qué escribes?» esanez, ondoan jesarten jatana. Harek be denpora zelanbait puskatu behar eta ez eustan izten ezer egiten. Baziren tartean berbarik egiten ez ebenak eta honeik bildurgarriago ziren, ez baitakizu zelako erreakzinoa izan daikien. Gelako hormaz beste aldeko komunetan, txizontzi lerroaren azpian jesarrita, hantxe aurkitzen neban kontzentrazino apur bat, bera be sarritan etena, txiza edo bestelakoa egitera edonoz sartzen zirenen aldetik. «Zer egiten dok hor?». Esplikaiozu orain zertan ari zaren. Gelakideak patiora ataraten dabezenean, bertan gelditzen izten badautsue, orduantxe idatz daikezu nasaitxoago, baina urtekera haretarako norbera be irrikatzen egon ohi da.

Erizaindegiko patioa teorian separatua izan arren, beste preso mota batzuk be biltzen ziren. Ez jat burutik joango bortxatzaileen talde bat, sekulako iskanbila etaraten ebana, kanta eta

dantza flamenkoak eskuzartatuz. Bazen bat, neskatxo baten eraztuna hatz eta guzti ostu ebana, lanak errezago egitearren edo. Erizaindegiko patiora etaraten ebezen, beste patio nagusietan istilurik gerta ez zeiten, bortxatzaileak oso gatxikusiak baitira presoen artean. Talde desafiantea begitandu jatan. Preso komunekiko biziera hain hurbila oso gogor egiten jat. Ordu batzuk eurakaz harremonean ondo eta pozik jasan ohi dodaz, baina gau eta eguneko hori, eta lagunak eten barik aldatuz, beste kontu bat da. Jente marjinatua, zigortua, sufritzailea, lagundu eta kidetzat hartu beharrekoa, noski. Hori guztia badakit, baina distantzia bako alkarbizitzak, alkarren ganeko bizitzak, hormek baino gehiago zapaldu ohi nabe. Preso politikoen edo norbere antzekoen artean be, alkargaintasun etenbakoak nahitaezko tentsinoa ezarten dau. Gizakiak, beste edozein animaliak lez, bakar-lurralde minimo bat dauka, zeina kentzeak izatea bortxatzen dauen.

Barrutik ez dakit zelan aurkituko zen, baina itxuraz behintzat Jon Idigorasek beste aire bat eta beste gailentasun bat agiri eban preso komunekiko tratuan. Sarreran izan ohi den «periodoa», hiru eguneko isolamendu «sanitarioa», ez daukat ahazteko. Aurreko espetxealdietan bakar periodoa ezagutua nebala, Basaurin baginen zortzi-hamar, hogei bat metroko literategi ia itsu batean, oin dobleko (ez dakit hirukoa ez zen) ilara bana alde bakotxean, erdian metro bat inguruko pasabideagaz. Eskerrak bonbila lorrin biren argitasun horilak zikinkeria disimulatzen eban, baina usaimena engainatzerik ez zegoen. «Munduko onenak hementxe junteu gozak, paisa!», esaten eban Jonek. Sartu eta bakotxa bere literan (manta honeik zenbat masturbazino lehortu ete dabe?) egokitu gineneko, baztar aldeko goiko literatik txipiroia lako karkaisa bati erreparatu neutson, zarata korroskatutik pasabidearen erdia plast jo ebana. «Munduko garbijjenak be hementxe junteu gozakela uste jjoat, paisa!», esan neutson Joni. Han bakotxa bere kakatzan zebilen eta ez zen tokia, etorkin barri bat garbitasun konpartitua aldarrikatzen hasteko.



Kontrasteen loriarako, bizitzak emon daustan bitartekotzarik xarmantenetako bat hantxe burutu neban. Gure patioak sukaldeetara emoten eban eta jente klase asko zebilen bertan bueltaka, gaztetxoak, gazteak, txakur zaharrak eta danerik. Mutil batek maitemin historia apasionatua kontatu eustan, baina gizajoak ez zekien idazten eta ea lagunduko neutson eskatu eustan, bere maitearentzat gutunak papereratzen. Arrastada batzuk egiten bazekien, baina eleganteago bialdu gura ebazen bere poemak, hauxe baitzen beste alderdi harrigarri bat, idazten jakin ez eta halako piezak sortzea. Ez dakit dezimak ala sonetoak ziren, baina ez ziren biko errimatu soilak, metrika zailekoak baino. Preso erdaldunak, nahizta analfabetoak edo eskola urrikoak izan, zelanbaiteko poesiara oso zaleak direla ikusi neban. Bertsolaritzan zelako-halako bertso batzuk jarteari hainbeste meritu emoten geuntsola, han ohartu nintzen ia edonork egiten dautsula ahapaldi sorta bat, teknikoki akatsik bakoa, hizkuntzaz eta edukiz maila jasoan eta batzutan orijinaltasun harrigarrian. Argi dago hizkuntza garatu batek maila horretan be ahalmen luzeagoa daukala, hiztun guztiakana heltzeko.

Basauriko espetxean egin neban «Zu ere bertsolari» liburuaren zirriborro ia definitiboa, gero xehetasun batzutan aldatu edo gehituko baneban be. Urteak igaro diren arren, metodo on bat delako inpresinoak jarraitzen daust. Izaten dira denporaren buruan «hau zelan ein najjoan nik?» esanazoten dautsuen lanak, baina liburu hau urteetan erabili izan dot gero eta ez daust inoz emon alboragarri izan daitekeen errezelorik. Metodo guztietan lez, ez dago markatzen diren urrats guztiak hitzez hitz eta xeheki garatu beharrik, baina, oro har, bertsoaren teknikaz jabetzeko eta praktikan bertso egokiak jarteko, baita hein batean inprobisatzeko be, gauza zarela sinesteko, guztiz balioko izaten darrai. Azken froga pozgarria Miamiko espetxe batetik iritsi jat, idazten ari nazen uneon hain zuzen, 1998ko udabarrian. Han preso dagoen errefuxiatu bateri pilotari lagun batek «Zu ere bertsolari» bialdu eutson eta handik denpora laburrera bertso dotoreak kaleratu ebazen.

## Bizkaiko bertsogintza (i) Izengabeak

ETOR argitaletxeak bertsolaritzaren historiaren plan handi bat proposatu eban, dozenaren bat liburuki mardulekoa. Bizkaiko bertsogintzarena niri eskeini eusten eta gustura hartu neban lana. Milioi biko ordain promesan, lan luzean abiatu nintzen, beste taldekide guztiak lez, bakotxa bere arloan. Urtebete inguruan material gehiena baturik eta sailkaturik neukanean, argitaletxeak porrot egin eban eta gure lanak urtenbide barik gelditu ziren. Nire material guztia karpeta potoloetako lozorroan urdindu zen, argiaren itxaropen barik, alperrik egindako lanaren lekukotza minberan. Batzuri eskeini be egin neutsen, dohan eta animugarri, hutsean gal ez zeiten gogoz, baina ez eban arrakastarik izan.

Urte batzuren buruan, Bizkaiko Bertsozale Elkartearen, Bizkaiko AEKren eta «Zenbat Gara» Kultur Elkartearen babesean, lana burutzeko ahalbidea ikusi neban. Falta nebana amaitzeko, zortzirehun mila pezetako aurrekontua aurkeztu neban eta onartua izan zen. Lehenengo planeko milioi bietatik milioi bat eta berrehun mila pezeta galtzen banebazen be, diru hori irabazitzat joten neban, ostantzean hutsa izango baitzen. Azkenean lortu genduen liburua argitaratzea eta niretzat, etsipenaren ondoren, sari eta garaipen handia izan zen. Liburuaren erdi bat Bizkaiko koplaritzak betetzen dau eta, urte batzuren buruan, lan harexeri esker osotu ahal izan dot hain maite dodan eta hain maitagarria dela uste dodan Bizkaiko kopla zaharren antologia, entzuleria mugatu samarren aurrean atsegin lotsabagez kantatzen dodana, bai bakarrean, bai musikariakaz, eta laster diskoan agertuko dena, formato musikal osoan.

## Bizkaiko bertsogintza (ii) Izendunak

ETOR proiektuan abiatu nintzenean, laster konturatu nintzen liburu bakarra estuegi geratuko zela. Lehenengotan bat osotzeko bildurrez hasi nintzelarik («topeuko ete jjoat Bizkaiko bertsolaritzen holako liburu bet horniduteko jenerorik?»), pare baterako materiala atara zeitekeela somatu neban. Argitaletxekoei liburu biren ahalbidea aurkeztu neutsen eta onartu egin eben. Beraz, bakotxa milioi bina zela, lau milioko lanean sarturik nenbilen. Larehun izan balira be bardin zen, porrot egitekotan. Izendunen materialean ez nenbilen hain aurreratua eta bigarren ahaleginean eta gorago aitatu babesleakaz, falta zena burutzeko milioi baten kontua aurkeztu neban eta halantxe onartua izan zen. Liburu bata eta bestea 1995ean amaituta zegozen. Bigarren hau, nire planetan beti atzeragarri gertatzen diren bideko ezusteakaitik, 1998. urteko udagoienean argitaratu zen. Azkenean neu bizi nazela burutu da orain hamar urte hasitako lana eta kobrantza, hau be norbera bizi dela eskertzen baita.



Bizkaiko bertsogintza izendunean larogeta hamar izen sartu dodaz, bertsolaritza nahiko zabal harturik. Zerbaitegatik izenburuan be bertsolaritza barik «bertsogintza» jarri neban. Bizkaiko tradizinoan plazako bertsogintza ez da hainbeste garatu mende honetara arte, hemengo jite nagusia koplaritza izan baita, nahizta badiren uste baino ezuste handiagoak. Bizkaieran idazle kultoek bertsoak jarteko joera handia euki dabe eta hortik dator hainbeste izenen zerrenda. Aboitiz, Gandara, Basterretxea, hiru Mogeldarrak (Joan Jose, Jose Antonio eta Bizenta), Eusebio Maria Azkue, Aita Uriarte, Arrese-Beitia, Kirikiño, Etxeita, Zamarripa, Txomin Agirre... Ia ez dago bizkaierazko idazlerik, bertsogintzan ahalegindu ez denik.

Izendunen liburuak gerrara arteko bertsogintza jasoten dau. Handik honanzkoari be ETOR asmoan liburu bat eskeiniko jakon, baina egin behar ebanak ez eban lan handirik aurreratu eta berak urten eban porrotetik freskoen. Txori geldia goseak hil daike, baina ez alperreko hegadak. Lehenengo biak eginak izanik, hirugarrenak, Bizkaiko bertsogintza garaikidea izango litzatekeenak, nonoz egileren bat aurki leike, baina apenas ni izan-

go nazen, ze, norbera historiaren barruko izanaz ganera, ez daukat gogorik, bizi nazela ikusiko ete dodazen dudazko lanetan barriro sartzeko. Ez dot ezezko biribilik jaurtiko, lehen be beharrizanak lan asko eragin izan daust eta. Beronegaitik ez balitz, ez dakit hutsetik asko urrunduko nintzen. Derrigorrak hanka bakarra dauka eta ezinak bat be ez. Batak zein besteak gauza bat dauke oso ona, zalantzarako bitarterik ez iztea. Beraz, libre zagoz intelektual imajinatiboei gustatzen jaken hautamena praktikatzeko denporapasatik. Derrigorra izan ez balitz, ez dakit jaio be egingo nintzen eta hori lastima izango zen.

## CD-ROMA ETA BESTE BATZUK

Elhuyar Kultur Elkarteak bertsolaritzari buruz CD-ROM bat egitea erabagi eban eta Euskal Herriko Bertsozale Elkarteagaz eta abar zenbait harremon izan ondoren, azkenean gidoi nagusia egiteko ardura neugana iritsi zen. Lana gustura egin neban, epe, ordain eta baldintza zehatzak baitziren. Bost arlo handi sartzen ziren lanaren barruan. Teknika eta bertsolaritzari buruzko iruzkin orokor zenbait; txapelketen historia eta balorapena; ehun bertsolariren aurkezpen biografiko eta artistiko bat; ehun bat bertso sortaren antologia; eta ehun doinuren beste bilduma bat. Formato honek bertsolaritzaren datu-base nahiko zabal honetatik bakotxak nahi dauena pantailara etarateko modua emoten dau, baita entzuteko eta nahi den testua inprimatzeko be. Lehenengotan uzkur samar eta erdi derrigorrean hasi banintzen, lan honetan parte hartu izanak atsegin handiak ekarri daustaz. Amaitu eta geroko atseginak edo alperraren atseginak esatera ninoan, gehienean gertatu ohi jatan lez, baina uste dot alperraren atsegina amaitzea baino gehiago ez hastea dela. Lan handi samar bat hartzerakoan, arrastaka ibilten naz bolada batean, etxea atzean geratu jakon marraskiloa lez. Ezin dot ekidin pentsamentuan dana batera pilatzerik eta halako baten derrigorrak etaraten nau zulotik, amaitutakoan gozamen bikotxa izango dodala jakiteak ez daust egunerako balio-ta. Azkenean egia da gozamen bikotxarena, baita hirukotxa be, kobratzekoa izan bada.



Beste lan batzuk be eginak izango ditut, EGINen *euskal gaiak* sailerako «Bertsolaritzaren Historia» laburra, «Bizkaieraz bertsotan» eta abar. «Eta abar» edo «beste batzuk» oso esapide pertxentak dira biak, gauza garrantzitsuen omisinoa iradokitzeko, ezer gitxi geratzen denean. Amaitu dagidan honetantxe, nekatzen hasita bainago egindako lanen ganean beste lan bat hartzeaz.

## BERTSO ESKOLAK

Larogeigarren urte inguruan hasita, bertsolaritzari zor dautsodan bizipenik ederrenetakoa bertso eskoletan aurkitu neban. Lehenengoa Bilboko Arte Ederretako lokal batean abiatu zen, Bilboko eta inguruko talde bategaz, urte oso batean zehar. Bertso eskolen eztanda ha ez zen izan nik beren-beregi bultzatua. Nonbait zabaldu zen bertsogintzan be zerbait ikas edo lan zeitekeela eta uste horren hedaeran euki neikeen parte bat, orduko hitzaldi eta harremon ugarietan beti horixe defendatzen baineban, baina bertso eskolen arloan eskeari erantzun besterik ez neban egin. Gaia polemikoa izanaz ganera (horrek sortu ohi dauen arretagaz), jente mota batek bere jakinmin oraindio difuso baten bideratzaile bat ikusi eban nigan, antza, eta urte batzutan gorakada euforikoa gertatu zen.

Bilboko lehenengoaz eta beste batzutaz ganera, gogora datordaz Eibar, Hernani, Elizondo, Iruñea, Donostia, Gasteiz, Eskoriatzako irakasle eskola, Udako Euskal Unibertsitatea... eta hemen bai itzi behar dodala benetako «eta abar» bat, ezingo baineuke danen zerrendarik ezelan be osotu. Sarritan oso jente ezbardina batzen zen, umeetatik zaharretarainoko eskilaran. Eibar-

koan, adibidez, udaletxeko areto nagusian uste dot, umetalde bat agertu zen eta nork esan behar eutsen, eurek zekarden ilusinoagaz, ha ez zela umeentzat pentsatua. Ikastarora etorrien artetik andereño moduko bat izentatu genduen, hareik ez baitzegoen dinamika orokorrean arretaz eta geldi eukitzerik, eta azkenean eurek aprobetxatu ebela gehien uste dot. Ikastaro luze eta kopurutsu hareitan adin, bizibide, buruera eta helburu oso ezbardinetako jentea batzen zen. Bertsotan apur bat zekienek kantatu egin nahi eben, beste batzuk kantatzera iritsi nahi eben, batzuk irakasle gisan zetozen, bertsolaritza eskolan zelan landu zeikien, beste batzuk bertsozale edo euskaltzale soilak ziren eta eurek be ez zekien garbi zer lortu nahi eben, baina danek zekarden halako espektazino baikor bat, ikastarotik zeozer handia ataratekoa.

Nahasmen haretan lehenengo zeregina ordena apur bat jartea zen eta uste dot nahikoa ondo lortzen genduela, jente sanoa eta borondate zabalekoa batzen baitzen. Beharbada kantatzeko irrikan zetozenak zapuztuko ziren apur bat, ez baitzegoen talde osoa kantatzeko gai ziren banaken entzule pasibo eukitzerik, baina honeintzat be aurkitzen genduen luzitzeko eta pozik geratzeko modua. Erdi hutsetik zetozenak, barriz, harriturik geratzen ziren zelan lortzen eben, hain denpora laburrean, puntu biko koplak egitea, baita lauko bertsoak be. Izan be, hutsetik neurri nahiko handiraino, aurrerakada ikusgarriak egiten dira, beharbada aurreratzerik itxaroten ez zelako, zorioneko bertsolaritza «berezkoaren» mitoagaitik. Orduan abioa bera da argumenturik bikainena. «Ezin dela ikasi? Zuek zelan ikasten dozue, ba?». Horrela misterio baten barruan sartu izanak, ustezko ezin bat menperatzen ari zarela ikusteak, urrats txikienak balentriatzat sentiazoten ditu. Aurreratzen dena asko izanik, kontrako aurreritxia dakarrenari askoz harrigarriago iruditzen jako. Bakotxak ikasten ebanaz ganera, hain talde bariatuan sortzen zen giro pozkor eta karinosoa bide zela, aro ha astinaldi erromantiko baten lilura guztiagaz gelditu da nire gomutan.



Ikastaro luze hareiz ganera, baziren trinkotzat antolatzen zirenak be, denpora mugatu batean hainbeste ordu eginez. Bai batzuren, bai besteen jarraipen lez, gehienetan eskola txikiagoak geratzen ziren, batzuk urteetan jarraituko ebenak. Talde txikiago honeikaz be asko ibili nintzen eta, bistan denez, beste era bateko lana egin behar zen, asmatzen hain errez ez zegoena. Hutsetik neurri handi samar bateraino arin aurreratzen da. Kopla txikiak ia bat-batean eta zortziko txikiak (hasbarriei zortziko handia betetzea askoz gehiago kostatzen jake) pentsatuta edo paperean osotzea nahikoa lorpen erreza eta animugarria da. Hortik aurrera, hots, dana bat-batean eta ritmo jarraituan kantatzera, urratsak askoz geldoagoak eta nekosoagoak dira.

Honetan interesgarria da Pello Esnalek proposatu eta praktikatu izan dauen metodoa, ezelako paperik bakoa. Sekretua batbaterako erreflexuak zuzenean lantzea da, memoriaz eta bakotxaren ahalmen inprobisatzaileaz beste bitarteko barik, hizkuntza bera ikasi genduen antzera. Metodo hau probatua dot, baita arrakastaz erabili be, eta oso aberatsa begitantzen jat. Halan be, metodo biak ez neukez alkarren eskluditzaile lez planteatuko. Bertso eskoletan, bat-batekotasunari buruz, oso ahalmen, helburu eta anbizino ezbardineko jentea batzen da. Ez da bardin, ezta antzeko be, umeen ala helduen talde bat eroatea. Umeek gehienean oso talde homogeneoa osotzen dabe, bai adinez, bai eskolaz, baita bertsolaritzari buruzko jarreraz be. Irudimen oso aktiboa euki arren, hartzaile pasiboak direla esango neuke. Harein jarrerarik aktiboena emoten jakena hartzeko «prestasunean» datza. Euren kabuz ez dabe eskatzen eta, eskatzen hasita be, ez dakie zer eskatu behar daben. Ume talde bategazko arazo nagusia pedagogikoa da. Ez da hainbeste zer emon, hau nahikoa errez erabagi baitaiteke, zelan emon baino. Zelan arreta erakarri eta eutsi, zelan bertsogintzaren zaletasuna eta trebetasuna era maitagarrian eta dinamikoan transmititu. Umeakaz edukia eta metodoak ez dira teorikoki gatxak, praktika bera baino. Behinena irakasle ona

izatea da, umeak artaz eta xarmaz eroaten dakiena.

Helduetan be irakasle edo arduradunaren trebetasuna beharrezko da, jakina, baina ez hainbeste. Hemen maila batetik aurrera bakotxak bere eskakizunak, bere interesak, bere helburuak askoz argiago daukaz eta bakotxak gauza diferenteak gura izan daikez. Arduradunaren zuhurtasuna taldekideen ahalmen eta interes ezbardinen diagnostiko argia eukitzea litzateke, ze azkenean, bitartekodun metodoz ala bitartekobakoz abiatu, une bat iristen da, non batzuk plazara begira dagozen, beste batzuk, barriz, bat-batean kantatzeko gaitasun bat euki arren, ez dauke plazarako anbizinorik, edo izaerarik, edo bueltan datoz, proba batzuk egin ondoren. Beste batzuk ez dira inoz izango bat-batean errez samar kantatzeko gauza eta anbizinorik be ez dauke horretarako, baina bertso eskolara pozik datoz. Eta azkenik beti dago eskolakide barrien joanetorria. Zer egin behar dabe lehenengoz datozenek urteetan dabizenen ondoan?

Bestalde, eskola askotan, batez be hirietan eta erdalgune handietan, bertsolaritzaz haragoko edo aurreragoko arrazoiek erakarri ohi dabe bertso eskolara, gehienbat euskeragaz eta euskal kulturagaz zerikusia daben sentimentuak bide. Orduan —eta gaurko bertso eskola askoren egoera eta erronka nagusia hortxe dagoela uste dot— maila, interes eta anbizino ezbardineko kideen gune bat da eskola. Orokorki oso talde homogenoa emoten dau (euskeraren eta euskal kulturaren militanteak, bertsozaleak, hainbat ekintzaren eragileak, politikoki be sarritan nahiko hurbilak), baina aurreratu ez da orokorki egiten, urrats zehatzetan baino, eta hortik etorri ohi da eskola askoren egoera estankatua, nondik jo edo zeri ekin asmatu ezina. Maila honetara iritsita, nahitaezko da bertso eskolako zenbait jardunen dibertsifikatzea eta horren araberako programakuntza, ikasturte osoarena edo denporaldi laburragoena. Zer egin danek batera, hau oso garrantzitsua baita taldetasunari eusteko, eta zer maila edo azpitalde banandu etan, horra gaurko bertso eskolen argibehar behinenetakoa.



Plazan kantatzen dabenen interes nagusia, adibidez, plazan dago. Zer landu behar dabe honeik espezifikoki, gauza frogatua baita «ekite» soilak ezer gitxi balio dauela? Astean pare bat orduko klasea tabernan, afarietan, lagunarteetan eta beste hainbat gunetan egin daitekeena praktikatzen gastatzea denpora erdi alperrik galtzea da. Zeri «ekin» behar dautso honelako ikasleak? Horixe asmatzen eta programatzen dago kakoa. Badago hamaika arlo. Errima oihan amaibakoa da, ideien lantzea hor dago, esateko erak, hizkuntz arazoak, adierazpenaren erregistro ezbardinak: indarra, erretorika, ironia, sentimena, solemnitatea... gaien trataera anizkotxa, topikoen gainditzea... Bakotxaren interesari dagokon gaia asmatu ezkero, eskolako lana aste osora luza daiteke, klasea bakotxak daroan-dakarrenari buruzko gogoeta eta ordenatzeko denpora bihurturik. Plazara begira dagozenei buruz esana beste guztiakaz be bardintsu aplika daiteke, maila bakotxari benetan interesatzen jakozen gaiak edo lanak asmatzeko gauza izan ezkero. Hortxe legoke arduradunaren artea, gero diziplina minimo bategaz konbinatu beharrekoa.

Bertso eskoletan gauza handiak egin ahal izateko, badago arerio handi bat: nekea. Gehienean jentea nekaturik etorten da, bakotxak eguna bere lanean edo ikasketetan sartuta. Horrez ganera, bertso eskoletako partaide gehienak beste jardun batzutan be badabizenak izan ohi dira, politikagintzan, euskalgintzan, kulturgintzan, edo herriko hainbat ekimenetan. Orduan kontradikzino bat sortzen da ahalegin handirik egin ezinaren eta ahalegindu barik aurreratu ezinaren artean. Orain arte ez dot metodorik aurkitu, dibertsino hutsez ikastekorik. Lortu behar dena da ahalegin ondo pasatzekoak aurkitzea, baina beti be ahalegin bat eginda, eta nekea lagun txarra da. Astean pare bat orduko lagun giro atsegin bat bertso eskolaren helburu on bat izan daiteke, baina inork ez dau horregaz bakarrik konformatu gura izaten, jakinki behintzat, nahizta gero sarritan horretaraxe mugatu. Orduan are beharrezkoago da programakuntza zehatz bat, klaseko ahalegina

aste barrura, bakotxa deskantsatuago dabilen uneetara luzatzeko. Etxerako lanak? Neurri batean bai. Horrela klase denpora aurrez egindako lan baten gogoeta, eztabaida edo praktika gunea izan daiteke, era lasai eta ondopasagarrian. Klase orduetan gauzatu ezin den ahalegina astean zehar banantzeko programa bat estankamentua ekiditeko era efikaza izan daiteke. Ostantzean benetako interesa sortzeko gaiak asmatu behar dira, egin barik libratzerik ez dagoen ahalegina nekosoegia izan ez daiten. Kakoa gustura nekatzea da.

Plazara begira ez dagozenen artean, bertsogintzako gai espezifikoez ganera, beste arlo asko landu daiteke. Bertso eskola gehienek bertso inguruko ekintza asko antolatzen dabe. Hor badago zer pentsatua: saio ezbardinak, gaiak eta gaiei buruzko gogoetak, aurkezleak, jaialdietako baldintzak. Batez be gaietan eta saioaren egitura eroateko moduan etenbako gogoeta gaia dago. Bertso eskola batean, eta lekuan lekuko preminen eta interesen arabera, egingaien zerrenda amaibakoa izenta daiteke. Egin behar dena da dibertsifikatu eta ahalik zehatzen programatu, beti be eskolako kideen interesakaz bat eginez. Batzutan edo batzukan ez dira interesak guztiz zehazturik egoten, halako jarrera orokor bat baino, eta bertso eskola on batek interes barriak sortzen asmatu behar dau. Oinarrizko ibilbidea egina dauen bertso eskolak nahitaez programakuntza aniztura jo behar dau.

Ni bertso eskola eta ikastaroetan atzera-aurrera hasi aurretik, Leintz bailarako Almen ikastolaren inguruan sortua zen mogimentu oso indartsu bat, Patxi Goikolea, Santi Iparragirre eta Joanito Akixuren bultzadapean. Nahizta batez be ume mailan lan egin, bertsolari helduak be inguratu ebezen eta hainbat ekimenen artean Apotzagako txapelketak etorriko ziren, heldu, gazte eta gaztetxo, danak nahastean eroateko modu guztiz herrikoi eta aberatsa asmaturik. Niri fenomenoa Euskal Herri guztira zabaltzen ikustea egokitu jatan eta hedapena hain arrakastatsu zihoan, ezen bertso eskolen egun bat ospatzen hasi ginen. Ez dakit zenbat urtetan izango zen, baina lehenengoa, Arraten egin zena, oso gogoan daukat, Basauriko espetxean harrapatu baininduen, larogeta bian. Bertso eskolen arteko txapelketak be antolatu ziren eta, oso oker ez banago, lehenengoa Mungiako pilotalekuan jokatu zen, Txiplas txapeldun geraturik. Niretzat mogida ha guztia ederra izan zen, bertsolaritzaren ilusinoa zabaltzeaz ganera, konfiantza eta adiskidetasuna sortzen baitziren. Bertsolari lez, entzuleakazko hartuemonak, denik hurbilena izanik be, bere distantzia dauka eta, niri dagodanez, askorengan ez neban sinpatiarik lortu. Bertso eskoletan, ostera, hartuemon luzea eta lagunkoia izanik, karino handiko giroa bizi izan neban, plazan nekezago somatzen dena.



Mogimentu haretan, abiagunean behintzat, sortzen ziren lehenengo aurreritxi edo itaun nagusiak hiru ziren. Alde batetik zelan zeitekeen beti «berezkoa» zela entzuna genduen bertsogintza ikastea. Bestetik ea emakumeak be bertsolari izan zeitekezen eta azkenik gauza bera euskaldun barriez. Bertso eskolara zetozenak, ez gitxi kostata batzuren aldetik, laster gainditzen ebezen aurreritxiok, eskolako dinamikan murgildu eta aurreratu ahala. Bertsotan ikasteari buruz, oso gogoan daukat jenteak zelako begiak edegiten ebazen, proposatzen nebanean:

—Hara! Honek konponbide erreza dauka. Ezin dela ikasi uste dauenak segi lasai etxera. Ikastaro hau guztiz borondatezkoa da. Baina probatzeko kapritxoa daukanari zin egiten dautsot hemendik hilabetera ez dauela hori usteko, bera harrituko baita gehien, zelan hainbeste aurreratu dauen.

Inork ez eban alde egingo, motibo horregaitik behintzat, eta denpora baten buruan itaunduko neutsen:

—Orain zer dinozue? Ikas daiteke ala ez?

Emakumeak bertsolari izatera heltzeaz be gauza bardintsua gertatzen zen, baina zelan han, mistotasunaren xarma jolaskor eta koloretsuan, danok batera gengozen, aurreritxiak laster

ezabatzen ziren. Zeure mahaian bertan, zu baino errezago aurreratzen dauelako miresten dozun andrazkoagaitik zelan jarraitu behar dozu ha ez daitekeela bertsolari izan tematzen? Bertso eskolen barruan ez zegoen ezelako problemarik, praktikak berehalaxe bihurtzen baiteban «berezko», bai bertsotan ikasi ahal izatea, bai emakumeak bertsolaritzan integratzea.

Bertsozalego orokorrean, ostera, ez zen gauza bera gertatzen, leku askotan emon nebazen berbaldi edo parte hartu neban mahainguruetan sobera ikusten zenez. Auzi bi horreik eten barik eta setati agertuko ziren beti. Aurkatasuna ez zen azaleratzen eskolabakoen artean bakarrik, zeintzuek gehienean pasiboki entzuten eben. Jente kultoa eta karreraduna zen muzintiena, baita agresiboa be askotan. Ondino batzuk ez dauste parkatu bertsolaritza ikasgarri dela zabaldu izana. Emakumeak plazako bertsolari izatera heltzeak, barriz, txilibitu magikoa zirudien. Ari zirela, etorriko zirela, honelako mogida batek, figurak emoteko, bere denpora behar ebala eta abar entzutean, irribarre burlosoz jaulkiko eben segurantza kontserbadoreen arrazoi arlotea: «Kosta behar zaik orain arte gertatu ez dena ikustea». Kostatu zen, bai, ze, urte batzuk joanik, neu be desanimatzen hasia nintzen, oso dotore zetozen neskak, adin batetik aurrera, ezkutatu egiten baitziren danak. «Hik esaten huen, baina hemen ez zatorrek inor» entzun behar izan neban han-hemen. Barriro be denpora eskatzen neban, esanez ze, bertsotarako gaitasunaz ganera, beste faktore asko zegoela tartean eta etorriko zela eguna, danak gainditUak izango zirena, baina, egia esan, neuk be zalantzak izan nebazen. Gaur, zorionez, kontu guztiok historia gainditua dira.

Euskaldun barriena be gaur ez dau inork kuestionatzen. Moltzo honetatik figurak sortzea andrazkoen artetik baino gatxago da, euskeraz ondo ikastea nahikoa erronka izanik, gero ganera bertsolaritzaz aktiboki xarmatzea oso kopuru mugatuaren erokeria da-ta. Honetan penarik handiena «Txinotxu» esaten geuntson Juan Isasigaz hartu neban. Haren eboluzino bizkorrak eta bertsotarako agiri eban dohaiak harritu egin ginduzen eta hara non berak irabazi eban Arabako lehenengo txapelketa, Bizkaikoa izan arren, Gasteizen baitzegoen orduan bizitzen. Poz handia hartu genduen. Euskaldun barri bat txapeldun! Badakigu Araban maila handirik ez zeitekeela izan, baina «Txinotxuk» bertsotan dotore egiten eban eta ale batzuk harrigarriak botaten ebazen. Txapela irabazi eban eta zeharo ezkutatu zen. Ez dakit zergaitik, beharbada pasatu eban estutasun edo ganean sentitu eban erantzukizun handiegiagaitik, bertsolari ez izatea erabagi eban. Handik urte batzutara, Abadiñoko San Blas Hostalean alkarregaz topo egin genduen eta, zelan ez, autua etara neutson, erabagi ha berpentsatu egin behar ebala eta abar. Gogoratu jatazen arrazoi intelektual, militante eta sentimental guztiak jaulkiko neutsozen eta berak ez eban ezetz garbirik esaten, segurrenik zuzenean ez jarkitzeagaitik, baina gehiago ez dot entzun inon kantatu dauenik. Parkatuko ahal daustaz «Txinotxuk» lerrook, baina egia da bertso eskoletan haren erabagia ilusino baten moztea izan zela. Harrezkero, zorionez, euskaldun barrien kontu hau be gainditutzat eta ahaztutzat jo geinke. Gaur egun bada hainbat euskaldun barri, bertsotan tiki-taka dabilena, baita plazan be neurri polita emoten dauena.



Beti pentsatu izan dot («pentsatzen» hasi nintzenetik, jakina) «berezkoaren» kakoa, ikasi ezinaren ustea baino gehiago, besteek ez ikastearen komenentzia ez ete zen. Irakasteak konpetentzia zabaltzeko arriskua baitakar! Alde horretatik uste klasikoak arrazoi osoa zeukala egiaztatu dot, orain, zabalkuntzari esker, neure burua zelai hegalean ikusita. Berezkoaren teoriak praktikan jarraitzera, gaur be erdirago ibiliko nintzen zirkuitoan. Zabaltzen dozun haizeak ezkutatuko zaitu. Baina haizea neugaz geratu zen.

1980ko txapelketa ostean, bertso eskolen abiatze euforikoaz ganera, hainbat hitzaldi eta bakar-saio izan neban baztarretan, entzule eta herri motarik ezbardinenetan. Final osteko laino oraindik fresko eta ameskorrean, Durangoko Ikastolatik deitu

eusten, ikasleen aurrean ordubete inguruko hitzaldi-ekitaldi bat egiteko.

—Zelan gur'ozue?

—Zeuk gur'ozun moduen.

Dana norbere askatasunean iztea dana norberak egin beharra izaten da, baina erdi ipuin, erdi kantu, entzule txikien aurrean sekula ez naz bildurtu, aitzitik ostera, bertsogintzari berebiziko deritxot, norbera be erdi ume bihurtzeko. Joan nintzen eta, zer mailatako umeak eta gitxi gora behera zenbat izango ziren itaundurik, plan erreza eta atsegina ikusi neban. Gero txikiagoek be gura ebela eta abar, azkenean danak etorri ziren. Eguneroko arruntasunetik edozein nobedade da deigarri. Areto nagusia ganezka zegoen, zazpi urtetik hamairu-hamalaurainoko ehundazak umez.

—Honek danok zelan euki bi'otaz adi?

—Zu trankil. Irakasleok pareuko gara lekuan-lekuan da geuk kontroleuk'uz.

Borondatea bai, baina halako umeteria isilik eukitzerik ez zegoen, demoninoa narru gorritan erakutsita be. Aurre aldeko moltzo bat dominatzen baneban, atzeko eta hegaletako burrundadari hor konpon egin neutson. Banenbilen errima kontua zelanbait azaltzen, umeek ulertzeko moduan, «alkarren antza edo soinu bardintsua dauken, alkarregaz bat datozen, alkarren lagunak diren berbak» eta honelako definizinoak emonez eta oinen adibideekin bertso batzuk neuk kantatuz. Txaloan eta oihuan ez zegoen zekenkeriarik, burrundada handiagoa etarateko aukera zilegian. Hatan, hots egin neban:

—Aupa! Orain zeuek! Nik berba bat esango dot eta zuek segi. Ea beste zenbat berba topatzen dozuezen, haregaz errimatzekoak. Adi! Banoa! **Mutila!**

—**Neska!** —oihu egin eban zortzi bat urteko zaparro batek, ikubila aidera jaurtiz.

—Ona! Horreik biak oso ondo konpondu leiz alkarregaz, baina erriman beste konpontze mota bat esan gura dogu.

Ez dakit zelako azalpenak emongo nebazen, baina bai ederto gozatu mutiko haren okerra argitzen. Berezkoa? «Mutila-neska» errimatzeko afana daukanari ez dago gatx beste erlazino batzuk ulertuazoten.

## Gaiak eta gaijartzaileak

Inoz gai jartea lan erreza dela eta saio kaskarren errua gehienean gaiena dela esan dodanean, gai jartzaile batzuk hasarratu egin dira, baina egia delakoan nago. Puntako bertsolarien kartel batean nire buruan ez da sartzen saio luzitua ez atarateko kasurik. Ezta maila beheragoko bertsolariakaz be, gaijartzaileak harein neurri eta ahalmenera egokitzen badaki. Hain gatxa al da? Gai jarteaz gogoeta egiteko, Bizkaiko Bertsozale Elkarteak antolaturik, Muxikako Ariatzako eskolan egin genduen jardunaldi batean, orri eskematiko hauxe zabaldu neban:

### G A I A K

(Ohiko saioak. Txapelketak beste kontu bat dira).

I) UMOREA / SENTIMENA / DRAMATISMOA > I R O N I A: Hiru esparruok ez dira definizino tekniko bat, orientabide bat baino. Hiru tonu konbinagarri. Ironia danetara hedatzen da.

II) UMOREA: 1) Txarto ulertua: gai arinak, garrantzi bakoak, «txorradak».

2) Hobeto ulertua: egoera pisudunagoak, entzuleengan erreferentziak daukezenak, edonor eurakaz identifiketakoak.

3) Izan daitekez gai garrantzitsuak, bertsolariengan eta entzuleengan pisu handikoak. Politika eta politikariak.

SENTIMENA: Ez dago zehaztu beharrik. Mila eratara eragin daiteke.

DRAMATISMOA: Ez da tragedia, tristura, hileta... Bai indarra eta kontrastea. Indarren kontrastea. Gai indartsuak, edonoren izate eta sentikeraren alde garrantzitsua jotekoak.

III) SAIOAREN IBILBIDE PROGRESIBOA:

1) LEHEN ATALA. Ordu lauren-ordu erdi. Saioaren tenperatura lortu.

a) Lan arriskutsuak saihestu: puntua, bakar gaiak, proba bitxiak...

b) Gai gorpuzdunak. Nahizta umore klabean izan, ez huskeriak. Bertsolariak luzitzeko modukoak. Gai konbergenteak, paraleloak.

c) Danai bardintsu kantatuazo. Danak berotu behar dira.

2) SAIOAREN GORPUTZ NAGUSIA. Atal honetan proba mota guztiak daitekez. MATXINSALTOKERIA saihestu. Bariazinoa ez da entzuleak eta bertsolariak mareatzea, gaien tonua (umorea, sentimena, dramatismoa) atzera-aurrera eten barik aldatuz.

3) AMAIERARANTZ. Saio ona izan bada, edozein azken da ona. Txarra izan bada, erremedio gatxa dauka. Oro har, azken atala = DISTENTSINOA.

**Gogoratzekoak:**

1) Hiru esparruak proportzino ezbardinetan, plazaren arabera.

2) «Ondo pasatzea» = dana umorezko gaia = txorrismoa. Saio onagaz pasatu behar da ondo. Horretarako hiru esparruak konbinatu.

3) Bakarreko saioak garrantzitsuak. Zegaitik kentzen dira sarritan?



4) Ofizioetan: dialektika frontala, paraleloa eta konbergentea.

5) Non eta noiz kantetan dogu? a) Lekuan lekuko informazinoa. b) Euskal Herrian gagoz. c) Gaurkotasuna.

6) Gai handiak (lana, laneza, euskara, presoak...) ez zuzen, milaka egoera posibleetariko batean baino. Betiko gaiak egoera barrietan.

7) Gaiaren kokapena, kontestu ezaguna, helduleku lagungarri ugarikoa.

8) Bitxitasunak, aproba barriak, esperimentuak onak dira neurriz, saioa desorientatu barik. Eta segun zein plazatan!

9) Bertsolariei saioaren egitura (ez gaiak) jakinazo. Modalitateak, ordena, lan bereziren bat, lekuko informazinoa eta abar.

10) Gaiak ondo emotea erraza da. Bertsotan ondo egitea da gatxa. Ebidentzia hau alderantzituz joatea gaijartze okerraren adierazgarri da.

Saioaren ibilbide progresiboak esan gura dau lehen partean bai bertsolariak, bai entzuleak berotu eta erakarri egin behar direla. Horretarako ohitura batzuk (agurra, adibidez) errespetatu egin behar dira eta gaiak luzitzeko modukoak eta garrantzi apur bat daukenak izan behar dabe. Umore klabean tratatzekoak, gura bada, baina pisudunak, ez txorradak eta ganera alkar menperatu beharreko obligazinoan jarriak. Eta bertsolari guztiek berotu behar dabe! Beraz, danei bardintsu lan eragin behar jake. Badira maniak, bariazino txotxoloaren izenean, agurren ordez ez dakit zelako bitxikeriekin hastekoak, edo zapla gai bakarrean edo puntuei erantzuten ipintekoak. Zelan emongo leuke pilota partidu batean esku berotzea kentzeak, edo etapa bat mendate gogor bategaz hasteak, ikusleen bariazinorako? Jenero bakotxaren abio naturala apurtzerik ez dago, jeneroa bera apurtu barik. Ezin jako pilotariari eskuak berotu barik jokatuazo, ez txirrindulari bateri mendatea ahotik sartu, ez dakit zein gidoi imajinatiboren izenean.

Bertso saio baten hasieran gauza asko egin daitekez, baina inoz be ez bertsolariaren kontzentrazinoa eta entzuleen arreta handia eskatzen daben lan estuak. Horretarako gero dago denpora. Eta estu-zabala bertsolariaren baitatik hauteman behar da. Askoren pentsakera da: «Gai arin batzukaz hasiko gaituk, apurka-apurka berotuz joateko». Gai «arinak» orduan garrantzi bakoa, txolin samarra esan gura izaten dau. Horrelako gaiakaz berotzea uste al dozue bertsolaria eta entzulea? Eta ganera segurrenik ofiziotan emondako gaiak dialektika frontala eskatuko dau, alkarren arrazoiak apurtzen ahalegindu beharrekoa. Esaterako: «Hik, Urlia, kontua eskatzean, Sandia tabernariari ez dautsok ordaindu gura, bazkari guztia euliak uxatu ezinik egin dokela-ta». Gai honek beste une batean beharbada joko dotorea emon leike, baina saio bat hasteko nekez. Gerta daiteke salbuespen jenialen bat, baina normalean horrelako gaietatik ez da gauza handirik etorriko, gai hutsala izanaz ganera, alkar anulatu beharrean aurkitzen direlako. Gai bera honela luzigarriago izan daiteke: «Hi, Urlia, bazkaririk ordaindu gura ez dauena haz, denpora guztian euliak uxatu ezinik egin dokela-ta. Hi, Sandia, euli horreitako bat haz». Hemen behintzat, huskeria beraren barruan, bakotxak bere bidea eroan daike, bestearena mozteko obligazino barik. Baleiteke bidean alkarregaz trabatzea, baina paraleloan emondako gaiak berak ez dau derrigorrrik ezarten, lehenengo formulazinoan lez, non biek, halan hotz-hotzean, alkar anulatzeko arriskua dauken, edo gehienez be bietako bat bestearen lepotik luzitzeko. Txorradakaz nekez lortuko da biak altu geratzea eta nekezago entzulea berotzea, nahizta bertso politak bota. Eulikeriek nor berotuko dabe, ba?

Saioaren gorputzean aitatzen den «matxinsaltokeriak» beste mania bat salatzen dau: bariazinoaren edo saioaren martxa ezustekorraren atxakiz, gaitik gaira giroak aldatzen ibiltzea. Bai umoreak, bai sentimentuak, bai dramatismoak, jarraipen minimo bat euki behar dau. Dalako giroa, kostata lortzen dena, esplotatu egin behar da eta, aldatzeko orduan be, ahal dela, jauzi nabarmenik ez da komeni. Oraintxe eguerdia eta oraintxe gauerdia ez da ezetan naturala. Kontrastea bilatzea ondo dago, baina ez belarrondokoa. Ezin da barretik negarrera, negarretik sentimentura, hemendik barriro barrera, barretik dramatismora eta abar, matxinsaltoka ibili. Bertsolarien eta entzuleen aldartea ezin da batera eta bestera dantzatu, trapuzko panpina bat txakur jostariaren ahoan lez. Hori, bariazinoa barik, triskazinoa da.



Dekalogo gisan doan zerrendan ez naz luzatuko. Puntu batzuk osotuko dodaz soilik. Hasierako UMOREA / SENTIMENA / DRAMATISMOA > I R O N I A . Lehen aginduak dinonez, gaijartze on batek hiru esparruak konbinatu behar ditu, beti be, plazaren arabera, proportzinoak aldatuz. Ez da bardin herriko plaza, zinema, afalostea edo pilotalekua. Hau bigarren puntuari loturik doa. Sarritan emoten dau, «ondo pasatzeko», dana umorezko gaia izan behar dauela. Hori txorrismoa da, batez be, umore atxakian, huskeriak erreskan datozenean. Umorea egiteak ez dau esan gura garrantzi bako gaiak edo egoera artifizialki zelebreak jarri behar direnik. Hirugarren puntuak dinonez, ez dakit zergaitik, saioa «arintzeko», bakarreko gaiak kentzen diren, hain espektakularrak izanik, asmatu ezkero. Ez dakit bakar gaiek zergaitik dauken astun edo gogaikarri fama hori. Eta gitxiago dakit zergaitik askok uste dauen bertsolari batzuri ez jakela bakarreko gairik ipini behar. Edozein bertsolariri jar daitekioz hamaika gai, sentimentu, dramatismo nahiz umorezkoak, danak ondo luzitzeko modukoak. Laugarren puntuak dino, ofizioko gaietan, ez dela nahitaezko, ezta komenizko be sarritan, dialektika frontala edo alkar apurtzekoa jartea. Badagoz dialektika paraleloak, non bakotxak bere gaia daroan, bestearena menperatzeko obligazino barik, edo dialektika konbergenteak, non biek itu bererantz apunta daikien, alkarrena indartuz.

Seigarren puntuak gai «handien» kontua aitatzen dau. Esaterako: «Bihar hemendik pasatuko den Korrikari hiru bertso». «Bihar Maiatzaren bata». «Herriko jaietan ezin doguz ahaztu falta

direnak». «Indian eztanda nuklearrak probatzen diharduen bitartean, inguruan hainbeste milioi gosez». «Langabezian dagozenei bertso bi». Eta abar eta abar. Gai honeik, honela erdi abstraktuan formulaturik, betikoak eta topikoak dira, bardinak orain hamar urte, iaz, aurten eta hemendik hamar urtera, bertsolariari askotan kantatzea egokitu jakozenak. Gai inportanteak izanik, bertsolariak topikotik zerbait diferentea gura leuke, baina azkenean ideia eta bere burua salbatzera joko dau. Izan be, gai horreik ideiak dira gehiago egoerak baino, edo egoera orokorregiak eta errepikatuegiak, obligazinozko gauza batzuk esatearen segurantzara zaroezenak, fribolizatzen hastea oso kaltegarria izan daiteke-ta. Hain gai zabalak egoera mugatuago eta konkretuago batean aurkeztu behar dira. Esaterako, Korrika dela-ta: «Bazoaze Korrikan eta bide baztarretik begira dagoen agure batek itauntzen dautsu: Nora zoaze horren prisaz?». Orduan Korrikaren betiko gai orokorrak heldulekú zehatzak eta diferenteak daukaz. Pertsona hori agurea, umea, turista ingeles bat ala zoro bat izan, gaiak oso bide diferentea hartzen dau. Honelako azpiegoerak asmatu behar dira, bertso diferenteak kantatzeko zerroa emoten dabenak, bide batez Korrikaren arrazoi handiak eta gehienean jakinak kontestuan tartekatzeko moduan. Bardin beste edozeintzuk gai handi eta orokorretan.

Azkenengo puntua beharbada mingarri begitanduko jako zenbaiti, baina halantxe sentitzen dot. Gaiak ondo emotea lan erreza da. Bertso onak kantatzea da gatxa. Orain badirudi gaiena be ez dela hain erreza eta arrazoi izango dabe. Segun norentzat izango da dana. Bertsolari batentzat bertso bat egitea, zelako-halakoa, munduko gauzarik errezena da. Gehienentzat, ostera, bertso bat osotzea miraria baizen gatxa da. Nork dauka arrazoia? Gai jartze kontuan bardintsu gertatzen da. Erreza da, baina sen bat behar da eta gauza txiki mordo bat jakin behar da, edo, zuzenago esateko, barrutik bizi behar da. Alderdi asko bistakoak eta naturalak dira, baina ikusteko gauza izan behar da, zeozer barria eta orijinala bilatu nahiak saioa izorratu ez dagian. Badira



egin behar ez diren gauza bistakoak: bertsolari bat denpora luzean isilik euki, bost lagun puntuka batera jarri, bost edo sei bertsolari batera ofizioan atara, hasierako agurrak kendu eta ez dakit zein era bitxitan hasi, agurren ondoren eta atzean bertsolari piloa dagoela, lehenengo kolpean bakar lanera deitu, edo lehenengo lanean puntu bati erantzunazo, parean joten ez badau, desmoralizaturik baztarrera joan daiten. Eta abar. Egin behar diren gauza bistako batzuk be badira, esaterako, bederatzigarren puntuak dinona. Hain gatxa al da bertsolariei saioaren egituraren eta kantatzeko ordenaren eta modalitateen informazino bat emotea, nori zer lan klase eta noz tokatuko jakon jakitun egon daitezen?

Gaien egokitasunaz ganera, gai jartzailea, figura lez, desdoblatu egin behar da. Gauza bat da gaiak jartea eta beste bat aurkeztea. Izan daiteke gaijartzaile ona eta aurkezle txarra edo alderantziz. Aurkezpena oso garrantzitsua da, bai bertsolarientzat, bai entzuleentzat. Gaiak ez ezik, aurkezlearen figura be eztabaidatu eta landu beharrekoa da. Esperientziak dino jente aurrean paratzen diren gai jartzaile asko aurkezle txarrak direla, nahizta eskuan gai onak euki.

Gauza guztiok xeheki eta astiro gogoetatu beharrekoak dira eta bertso eskoletan gitxienez langai garrantzitsuak izan behar leukie. Astiro eta xeheki, alegia, oso diseinu konkretuen ganean zentratuz. Ez teoria orokorren indeterminazinoan, gaiak euren formulazino egizkoetan eta saioak euren eredu konkretuetan eztabaidatuz baino. Har saio jakin bat bertsolari jakinakaz, erabagi zirkunstantziak (barrua ala kanpoa, herria, motiboa, entzuleria prebisiblea) eta egin saioaren gidoi osoa eta gero eztabaidatu. Gai hau zergaitik da ona, txarra, ez ona ez txarra? Saioaren bilakaera zergaitik da ona, txarra, arraroa, aldrebesa? Batzutan, gaiak beste ordena batean jartea nahikoa da, osotasun hobea atarateko, ordena edo progresinoa oso garrantzitsua baita. Berba egin behar da, eztabaidatu, oso gauza zehatzen ganean, berez nahikoa erreza behar leukeen lana hain konplikatua izan ez daiten. Eta, jakina, gogoeta guztiak egin eta gero,

edonor ez da gai jartzaile eta gitxiago aurkezle izateko gai, edonor ez den lez bertso bat zapla botateko gauza. Oraingo bertsolaritzaren gorabehera nagusietako bat gai jartea izanik, gogoeta gehiago eta zehatzagoa egin behar litzateke auzi honetaz.

Dinodan azkenik, eskemaren hasieran aitatu denez, txapelketako gaiena guztiz beste kontu bat dela. Nahizta kontsiderapen asko bardintsuak izan, hemen bai bertsolarien tentsinoa, bai entzuleen arreta eta berotasuna, aldez aurretik lortuta dagoz. Gai hutsalak sendo gerta daitekez, espektazino anbientalaren ganean. Txapelketan gai txarrak izan daitekez, baina ez garrantzi bakoak, okasinoa alde guztietatik oso garrantzitsua delako. Horrez ganera, gai orekatuak emoten saiatu behar da, bertsolariak arradaki parekatuan probatzeko. Eta beste hausnarkizun asko, hemen zehazterik merezi ez dabenak. Liburuetako kalakak ez dau ezetako balio, gero gune jakin batzutan, bertso eskoletan, esaterako, gogoeta xehatua, sistematikoa eta jarraitua egiten ez bada. Beharbada nik esatea nahikoa izango da, ez dela egin behar etarateko, baina neu behintzat lasai geratzen naz, bertsolaritza modernoaren preminarik (eta gatxik) handienetako bat seinalaturik. Gauza bat gehiagori alperrik ekinagaitik, ez jat fama onduko.

## Saio integrala

Gaiakaz eta saioaren egituragaz zerikusi zuzenean, «saio integrala» izeneko modalitate bat proposatu neban. Izenburu arranditsu horren azpian, bertsolariak saioaren bilakaeran parte aktiboagoa eukitzea besterik ez zen planteatzen, hots, jarten jakonari erantzuteko aktore on bat ez ezik, zer jarri eta saioari zelako forma emon erabagiten dauen autore be izatea. Libreko saioan dana bertsolariak ebazten dau, gaidunetan, ostera, ez dau ezer ebazten. Danetik hutsera tarte luzeegia dago. Azken batez, bertso saio bat antzezpen antzeko zerbait da, egitura konbentzional bategaz. Zelako egitura? Emoten jakon modukoa. Pello-erantzuna dirudi, baina horrek esan gura dau edozein egitura eta garapen har daikeela, antzerkian lez. Antzerkia esatean, emonaldiaren argumentua eta erakuntza esan gura dot, ez inoz eginazoten diren pailazokeriak. Gura diren gaiak gura diren ordenan jarriz ganera, emonaldia osotasun batean pentsa daiteke, argumentu bakarrez nahiz askoz, bertsolari batek, bik, danek gidaritza eroanez, gai jartzailearen figura be erabiliz, entzuleen interbentzinoa posible eginez, hitza eta oratoria tartekatuz...

Bada hamaika modu dotore eta egoki, saioaren martxa «integralki» eroateko. Azken batez, egiteko gehiena bertsotan egiteaz ganerako beste guztia aukerakoa da eta bertsolariak, emonaldiko figura nagusia izanik, argumentuan parte aktiboagoa eukitzeko zenbatgura era dago, errezetik zailagora, segun zelako bilbea garatu nahi den. Honek ez dau esan nahi danek sistematikoki honelako saioak izan behar dabenik. Modalitate bat gehiago litzateke librekoen, gaidunen, mistoen eta izan daitekezen beste guztien artean. Azken batez, ez da eredu zehatz bat, bertsolariaren ekimenetik harako ereduen sorbide bat baino, oso konkrezino bariatuak euki daikezena. Saio batzuk egin ziren, baina ideiak ez eban ezelako arrakastarik izan. Nire kurrikulumean, ezertan hasi izanaz damutzeko beste motibo bat gehiago. Nozbehinka, oso salbuespenez eta nobedade gisan, halako muntaia baten edo besteren barri entzuten den arren, (Joan Maiaren eta Igor Elortzaren «bertso trama» esaterako, Josu Goikoetxearen kolaborazinoz), bertsolaritza ondino ez da autoretasun osoa asumitzeko gai. Egiten den lana miretsia eta ordaindua den bitartean, obeditzea emonkorrago da erantzukizun insegurretan sartzea baino.

## TXAPELKETA

Txapelketarik bai ala ez, arrazoien gorabehera barik, jarrera kontrajarrien grina izaten da gehienean. Norgehiago baten alde eta

kontrako eztabaidakaz, beste norgehiago bat planteatzen da, azken batez eztabaida bera be lehiaren forma bat besterik ez baita. Telebisinoek zeozergaitik esplotatzen dabez higuintzeraino, ahalbide hezkor oro suntsitzeraino, antagonismo batzutan biszeralak enfrentatzen dabezen debateak. Ez da ezer argituko, baina bai burrundada auditiboa (audientzia) zabaldu, eta hori entretenigarri da, batez be txotxolo paretan garen uneetan. Zenbat eta nahaspila ozenagoa eta berba gogorragoak kurutzatu, hainbat eta interesgarriago. Eztabaidak, edukiaz harago, forma bat dauka eta forma hori bistosoa da. Arrazoiak arrazoi, zelanbaiteko kontratasuna edo kontrapuntua garatzen ez dauen antzerkiak ez dauka ezelako tirarik.

Txapelketari buruz, sarritan eztabaidaren forma bera da deigarri, aldeko eta kontrako arrazoiak artifizialki kontrajarriz. Zergaitik aldekoak? Kontrakoak dagozelako. Eta zergaitik kontrakoak? Kontratasun barik ezer ez delako deigarri. Txapelketaren «aldeko» eta «kontrako» arrazoiena eztabaida faltsua da. Gehienik be, txapelketaren «arrazoiak» eta «arriskuak» kalifikatu beharko litzateke, hots, arrazoiak oker ulertzearen edo urrunegi eroatearen arriskuak. Beraz, arrazoiak eta arrazoien arriskuak. On orok daroa bere baitan okerraren arriskua. Baina planteamentu honek ez leuke xarmarik, ez baitauka forma deigarririk, posizinoak alde eta kontra jarki ezik. Orduan eztabaida bera bihurtzen da txapelketa mota bat. Lehiari buruzko lehia bat. Edo lehia bat ebaditzeko lehia bat. Jokatzeko gogo argirik ez dagoenez gero, tematu gaitezen jokoari buruzko ikamikan.

Txapelketa bertsolaritzaren forma natural bat izanik, zilegi litzateke bertsolaritzaren kontra egotea, baina bertsolaritzaren alde dagoenak ezin dau bere forma natural baten kontra egon. Bertsogintzaren funtsa, bere eite teknikoen eta ganerako apaingarri estetikoen azpian, lehia dialektiko bat da. Bertsolaria beti dabil bere kontrarioaren arrazoia ondu, gainditu, irauli, osatu, luzatu, hautsi, gehitu... (jar dagozen aditz lehiakor guztiak) guran. Entzulea be beti dabil bataren eta bestearen arrazoiak eta esateko moduak konparatzen. Norgehiago hori barik bertsoak ez dauka zentzunik, antzerki planoak edo kontraste bakoak ez leukeen lez. Alde horretatik kirol bat da. Pilotan «kontra» jokatzen da. Ez neuke jokatu gura irabazteko ahaleginik egin gura ez dauenaren kontra. Kirolean absurdua da irabazi gura ez izatea. Bertsoketak be tentsino hori barik ez dauka tirarik. Ezin dot bertsorik pentsatu, lagunaren edo «kontrarioaren» bertsoa gainditzeko intentzinoz ez bada. Bakarka ari nazenean, neure aurreko bertsoa hobetu guran, jaso guran nabil. Ahapaldiaren beraren barruko bulkoak be gorantz daragi. Horregaitik gura izaten dogu bertsoaren gailurra azken puntua izatea. Bertsolaritza lehia bat da, ez bakarrik bakotxak bere burua gainditu gura izatearen zentzun boluntaristan, formaz eta barne dinamikaz beste baten kontrako norgehiagoan oinarritzen delako baino.



Lehia estetikoa, noski. Ez nahastu arlo honetan lehiaren agerpen benetan krudelak diren norgehiago ekonomikoa, politikoa, militarra eta abar. Auzia lehiaren edukia da, ez lehia bera abstraktuki hartua, hezitzaile askok hain arinki eta ustez progresistaki erratzen daben lez. «Lehia izpiritua» edo «izpiritu lehiakorra» edukiaren eta helburuen arabera kalifikatu behar da. Ez da bardin arma lasterketan ala Donostiako maratoian lehiatzea. Lehiaren edukiak eta helburuak ondo bereizten ez dituen hezitzailea oso elementu sozial arriskutsua da. Hain zuzen, bereizketa zelan eta zeintzuk balioren arabera egiten den, horrexek erabagiten dau pertsona baten pentsakera, ideologia. Badagoz bertsolaritzaren eta antzeko jardunen lehia gatxesten daben humanista eskrupulosoak eta kapitalaren lehiari, ostera, aurrerapenaren forma naturala deritxoenak.

Puntuaketarik eta txapelketaren beste osagarri formalik berariaz izentatzen ez bada be, edozein saio da entzulearentzat norgehiago bat. Bertsotik bertsora eta saio osoan zehar, nahitaezko konparazinoa dabil. «Gaur hobeto jardun dok... Gaur bestea hobeto ibili dok... Gaur biok egon zarie itzel... Gaur biok dana

beharrean». Gaur, gaur, gaur... ezin da konparazinorik ekidin, esplizituki formulatzen ez bada be. Lehia horretan, bertsolaritzak gauza bat dauka ezein kirolek ez daukana: lehiakide biek hogeta bina egin leikie. Alegia, biek (edo parte hartzen daben guztiek) irabaz leikie, biek zapal leikie podiumaren gailurra. Saio ikusgarriro tematu baten ondoren, kontrario biek irabazle urtetea bertsolaritzako dialektikaren garaipenik ederrena da, gertatzen denean, gorengo atsegina emoten dauena.

Bertsolaritzaren berezko lehiari batzutan sailkapen forma emoten jako, txapelketa bihurturik. Orduan nahitaez batek lehenen, beste batek bigarren eta abar izan behar dau, baina bertsolaritzaren egintza ez da funtsean aldatu. Entzuleak ohiko saio batean egiten dauen ebaluaketa orokorrari forma konbentzional bat emon jako, puntuaketa baten bitartez. Txapelketa ez da bertsogintza ohikoari tentsino edo arreta gehigarri bat ezarteko modu bat besterik. Ez dau bertsolaritza lehia bihurtzen, berez lehia den jardun bati forma arautu bat emoten baino. Era asko dagoz, saio baten berezko lehia primarioari beste tentsino sekundario bat eransteko. Txapelketak egiten diren modukoak dira eta era askotara egitura daitekez, baina, txapelketatzat definitzen dogun eredutik harago, formula asko dagoz bertsogintza arruntari espektazino erantsi bat ezarteko, bai buruz-buru, bai taldean. Bertsolaria prest egon ezkero, ganerakoa samur egiten da. Horretan gara, ba, mutilak euskaldunok, saltsak antolatzen!

Auzia da bertsoketaren berezko izaerari lantzean lehia forma antolatuago batzuk emotea oso naturala dela, txapelketa gisan edo dana dalako forma deigarrian. Honelakotzat joten dodaz Sebastian Lizasogazko saioa telebistan, Peñagarikano eta Egañagaz Amalloko jaietan, gero bertso afari bilakatu ziren «puntako saioak» be pentsaera horrexegaz proposatu nebazen Mungiako bertso eskolan... Egia esan, ezin dot adibide asko ipini, txapelketatik kanpora ia praktika nuloa baitauka. Puntuaketa bera be ez da nahitaezkoa. Aitatu Lizasogazko telebista saioan ez zen irabazle-galtzailerik izentatu, baina entzuleek benetako lehiatzat hartu eben.

Behin Gasteizen, txapelketari buruzko mahainguru batean, Jon Maia moderatzaile eta hizlari Egaña, Jon Sarasua eta ni ginela, Sarasuari entzun neutson, berari txapelketaren aurrean barruak krak egiten baeutson be, beharbada halako ordubete edo biko saio jarraitu batean, gai egoki baten inguruan «hustea» onartuko leukeela, gaiak saltoka eta hiru bertsoren kopurura mugatu beharrean. Hamaika formetariko bat litzatekeen hau zeozertan konkretatzen ez bada, urteak eta eztabaidak haizezko kontzeptuei bueltaka joango dira.

Sarritan entzun dot kantarien, idazleen, margolarien eta, orohar, edozeintsu artistaren artean onena zein den erabagitzeko lehiaketa batek ez leukeela zentzunik. Bakotxak ei dauka bere ekarria eta kitu. Argumentu hau eta antzekoak oso distiratsuak izango dira, baina azpian sofisma bat ezkutatzen dabe. Alde batetik, artisten artean be badagoz lehiaketak, non bakotxak bakarrean egina epaimahai batera aurkezten dauen. Orduan lan bat saritzen da, ez artista «txapelduna». Bertso paperen lehiaketak eredu horretan sar daitekez. Baina bestetik eta batez be, lehiaketako artistek, bertso jartzaileek lez, ez dabe inprobisatzen. Inprobisazinoa oso beste arlo bat da, non lanaren sorkuntza bera den lehiakidetza. Idazleak eta artistak, orohar, bakartasun osoan burutzen dau bere sorkuntza eta kontzentrazinoak ahalik isolamenturik handiena eskatuko dautso. Beste kontu bat izango da gero sorlana edo emoitza nork eta zelan interpretatuko dauen jente aurrean. Ez da inondik be bertsolaritzaren kasua. Bat-bateko bertsogintza ez dago ulertzerik, sorkuntzan bertan lankidetza dialektiko bat suposatu ezik, nahitaez gitxienez bikote sortzailea eskatzen dauena. Ken bertsogintzari bere izaera konfrontatua eta jenero bat amaitu da.

Ez dinot inprobisazinoa amaitu denik, honen formarik ohikoena eta gure artean ezagunena baino. Badira eta izan dira inpro-

bisatzaile indibidualak, jente aurrean bakarka dabizenak, bakotxak bere fantasiak kantatuz. Bertsolariari oso gitxitan tokatzen jako bakar-jardunean inprobisatzea eta nik neuk, musikaren laguntasunez, oso maite dot eredu hori. Tolosako ihauteri batzutan gau osoa egin genduen holan, ni kantari eta Josu Zabala soinulari. Bizkaiko Ibilaldietan eta beste zenbait okasinotan be ordu luzeak egindа nago kantuan, dultzainak eta trikitiak lagunduta. Baina hau ez da gure bertsogintzaren irudi ohikoa. Are gehiago, euskal bertsogintzaren ohiko ereduan ez dago musika tresnarik. Helduko ete da egunen bat, bertsolaritza zelanbaiteko lehia edo norgehiagoka izango ez dena? Ez dakit, baina ni neu ez naz horretan ahaleginduko.

Txapelketaz harago, lantzean tentsino gehigarridun saio bat bertsolaritzaren izaera naturalari dagokona litzateke, baita kalitatearen altzagarri be. Ez naz hasiko urtean zenbat bider edo zer proportzinoz izan leitekeen alperrik proposatzen, ideia bera asumitzeke dagoen bitartean. Esajeratzeko arriskua? Ez dago esan beharrik. Gauza guztiek dauke euren neurri ez hain zehatza, baina bai zuzena, eta horretan sor daitekezen okerrak ez dira ezelan be lehiaren «kontrako» arrazoietan lerrokatu behar, itotzea ez den lez ura edatearen eta edan beharraren kontrako arrazoia. Txapelketari buruzko eztabaida gehienak txapelketa saihestu nahiaren gogoetak ez ete diren nago. Kopla zahar batek dinonez, «eragin eta beti eragin», direnei eta ez direnei, hain gauza sinple bat lanbrotzeko.

Beste kontu oso ezbardin bat da bakotxaren gogoa lehia ezbardinen aurrean. Bertsogintza aukerako erabagi bat izanik, zentzunbagea litzateke nor bakotxa zerbaitera behartu edo presionatu gura izatea. Auzia ez da indibiduala, jeneroarena baino. Bertsolari gehienakan bertsoari hain berezko eta bizigarri jakon lehiarako prestasunik ikusiko ez balitz, hori bai litzatekeela aztergarri. Gehienean umezaro, nerabezaro edo gaztaro oso goiztarrari loturik ezagutzen dogu lehiaren maiztasuna, ondino nortasun samur eta dependentzia handiko adinetan. Eroan-ekarria eta dana inork egin behar. Heldutasun eta maila bat (baita diru iturri bat be) lortua dabenakan zentzunik ez daukanak askoz gitxiago behar leuke adin ahulagoetan, lehiaren giza aldetik begiratuta behintzat. Bertsolaritzaren oreka naturalagoa litzateke maila eta nortasun helduak pasatzea lehiaren tentsino maizkorragotik eta umeak eta gaztetxoak, ahal dela, estuasunetik libratzea. Heziketa egokian, nortasun eginbageak eta egingaiak zaindu behar dira batez be eta, hain zuzen, joera alderantzizkoa da. Hori bai badela lehiaren aplikazino okerra. Gaztetxotan gogaitu arte lehiatu ondoren(«erreta gelditu ginen»), benetako ikuskizuna emoteko zortea eta trebetasuna lortu denean, zelaitik ospa egin guran. Lehia, bertsoaren forma naturaletariko bat lez barik, gailurreko bertsolari izatera heltzeko tranpolintzat, edo bertsolariek noiz behinka egin beharreko sakrifiziotzat hartzen deno, txapelketen eta generako lehiaketa posibleen eztabaida azpikoz gora dabil.

Auzia natural zentratzeko, gogoeta bera be beharbada banandu egin behar litzateke. Nortzuk dagoz lehiarako gogoz eta jarrera baikorrez? Nortzuk dira bertsolaritzari halako maiztasun batez tentsino gehigarri bat ezarteko okasino eta formulen ilusinoa daukenak? Horrein debatea nahi neuke ikusi, teorikoki oso laburra eta gogoeta gitxikoa izango litzatekeena. Mendizaleek atoan adosten dabe zein menditara igon, mendia danen sentikera delako. Zertarako behar dabe tartean altuerak bertigoa emoten dautsonik? «Hi! Inork ez daua etortekorik agindu, eztok? Itxiguk besteoi geure dema nasai gozatzen». Bertsolaritzako lehiara itzulita, dudan edo aurka dagozenen arrazoiak ulertzen dodaz, baina ez jataz interesatzen. Eztabaida beitez eurak euretara. Aldekoak be eztabaida beitez euren artean eta, nonor dibagatzen hasten bada, esan leitekio: «Hi! Pasa hadi zalantzatien taldera eta itzul hadi, segurtasun probisional bat daukaanean».

Segurtasunak ez dauka behin betikoa izan beharrik, batez be jarrera kontua denean. Gogoa eukitzeko obligazinorik ez dago,

baina badaukenen enbarazutik kentzeko bai. Umetatik erretiratu arte lehian ibili beharrik ez dago, lantzean bolada batean, edo lantzean saio batzutan, intentsitate berezi batzuk asumitzeko. Honeikaz egin behar dira txapelketak edo direnak direlako lehiaketak. Prestasun horretan ez dagozenek euki begie baztartzeko askatasuna eta jokorik ez interferitzeko elegantzia. Descartesen duda metodikoa segurtasun batera heltzeko jarreratzat proposatzen zen, ez dudari kategoria gidatzailea emoteko. Erantzukizun bat ekar leikien segurtasunak ekiditeko zalantza permanentea Matusalen baino trikimailu zaharragoa da. Bertsolaritzari gagokozela, larogeiko txapelketa aurrean objekzino bardin-bardinak jaulkitzen ziren, gaur, gura badozu, formulazino «intelektualagoan» aurkeztuak, baina barruan koko berbera. Hainbeste funtzino eta disfuntzino ez da behar, lehia sinple bat praktikatzeko.

## BERTSO JARRIAK

Bertsolaritzaren adar nagusi bietan (bat-bateko bertsoak eta bertso jarriak), zein den garrantzitsuago pentsatzen jarrita, ez dakit zer erantzun. Bertsolaritza klasikoan, oso oraintsu arte, «bertso barriak» askoz garrantzitsuago izan dira. Bat-batekotasunaren lekukotza handirik ez daukagu. Txirritaz aurrekoak bertso jarrietatik ezagutzen doguz gehienbat. Bereak be, bat batekotik gelditu jakuzenak, ezer gitxi dira jarrien aldean. Oraingo bertsolaritzan bat-batekotasuna nagusitu da, ibilbideak, komunikabideak, gizarte urbanoagoa, bizieraren azkartasuna eta abar bide direla. Bertso jarriek arrakasta galtzeko arriskua neurri bateraino egia bilakatu da. Sariketa ugari antolatu arren, gehienak promozino mailan geratzen dira. Salbuespen dira sona bat lortzen daben sortak. Halan be, aldatuz doan mundura gura diren egokitzapen guztiakaz, bertso jarriek bat-batekoen aurretik joaten jarraitu behar dabe beti. Oreka horreri eutsi ezik, bertsolaritzak asko galduko



leuke, bat-batekotasuna, erreferentzia aurrelari hori barik, degradatu egingo litzateke-ta.

Bizitzan zehar bertso ugari jarri izan dot, asko neure kabuz eta ez gitxi eskariei erantzunez. Azken urteotan ez dot gauza handirik egin, ez dakit burua beste gauza batzutan darabildalako, ala motibazinorik aurkitzen ez dodalako. Beharbada nire barruko maizterren batek pentsatuko eban: «Itxijjok biher horreri, lehen be nahikoa ein dok erdi alperrik-eta». Lan honegaz batera, inoz liburuetan agertu bako sortak (diskoetan eta han-hemen sakabanatuak) eta karpeta zaharretan gordeta neukazenak bateratu nebazen, hemen gehigarritzat eransteko, baina azkenean, bilduma luzeegia litzatekeela ikusita, aparte argitaratzeko gorputza daukela pentsatu dot. Badira batzuk lehenago argitaratuak, gero bertsino aldatu samarrean emonak. Honeik eta danak jarraian emonez, lasai gelditukoi naz, zirriborro zaharrak iraupen segurrerantz hustuta. Badira urte batzuk, egiten nebazen lanak, batez be enkargukoak, gordetzen hasi nintzena. Aurretik bat edo beste gordeko neban, zeozer garrantzitsua-edo uste nebanean, baina beste ale asko eskatzaileen eskuan egongo dira, galdu ez badira. Bilduman ez dodaz danak sartuko, zeozergaitik interesgarri begitandu jatazenak baino. Argiaren zain geratzen dira.

Bertso jarrietan, neurekiko behintzat, mota bi argi bereizten dira. Batzutan jasotako gaiak eta xehetasunak bertsotzen ditut, «Laurehun Herri, mila bertso berri» izeneko liburuan agiri diren herririk herriko kondairak lez. Honelakoetan areago da kronista lana, beti be norbere estiloz eta ezaugarriz hornitua, informazinoa norbere erara moldatua eta garatua, baina gai emon baten ganean. Bertso jarri mota hau bat-batekotik hurrago dabil, nire kasuan behintzat. Izan daiteke, noski, motibo bat nonondik jaso eta dan-dana norbere elaborazino izatea. Azken batez, nonondik derrigor jaso behar da zeozer, lanik pertsonalena bada be. Ez naz horretaz ari, bertsotan emoten den informazino guztia edo gehiena, xehetasun eta guzti, jasoa denekoaz baino. Lan honen

gatxena informazino ona eta ondo jasotea, gero selekzionatzea eta azkenik egoki ordenatzea izaten da. Behin hori eginik, bertsotan jartea nahikoa lan bizkorra eta gozagarria izaten da. Bertsolaritza klasikoan, ezkontza galdutako bertsoetan adibidez, oso erabilia izan da eredu hau, non batek historia oso bat daroatson bertsolariari, honek, ordain baten truke, «bertso barriak» jar zegizen.

Beste bertso jarrien motan, ostera, dana norberak egiten dau, bai gai eta bai lantze. Orduan motiboak zeozergaitik norbera ikutzen edo arduratzen dauena izan behar dau. Honelakoek argi daukat ez dabela bat-batekoen mekanikara lotu behar. Bertso jarriaren xedeak ez dau izan behar bat-batekoaren kalitate gorena, eredu ezbardina baino, gero beharbada bat-batekoa be arrastatuko dauena. Hemen, inprobisazinoaren berme gisan, azkena pentsatzea da lehenengo. «Atzekoz aurrera» pentsatze miragarri hori, azken batez inprobisazinoaren segurantza sistema bat besterik ez da. Bertso jarrietan jardukera horrek zentzun gitxi dauka. Ahapaldia goitik beheraino egin behar da, ez azkenaren arabera. Goitik behera paperean, baina beti be ahapaldiari gorantz tiratuz. Bat-batean amaitzat ondo letorkeena abiaguneztat harturik, ahapaldia gorantz garatzea eta erremate on bat aurkitzea oso beste metodo bat da. Inprobisazinoan ez dago ahalmen bilatzailearen aurkikuntzei itxaroteko astirik. Hemen ezinbestekoa den betelanak bertso jarrietan ez dauka tokirik, edo oso urria behar leuke, beti be osagai estetiko gisan.

Bat-bateko modari jarrai segurrenik, bertso jarrietan oso neurri luzeak erabilteko seta sartu da. Korrontearen aintzindaritzat (edo erruduntzat) neu jo banaikie be, pare bat argitasun emon barik ezin dot itzi. Alde batetik, ondo bereizi beharra dago bat-batekoa eta bertso jarria. Neurri luzea ikusgarri bilaka daiteke bat-batean, batez be txapelketan, eta alderdi hori esplotatzea ez dot txarto ikusten, nahizta oso gatxa den hain espazio luzea eduki onez eta eroangarriz hornitzea. Betelan luzea egin behar da, errima egokiz eta progresino gozagarriz burutzea oso gatxa delarik.



Sarritan bertso luzeak, esatekoa azken puntuan edo azken bietan kargatzen jakenak, askoz hobeto eta orekatuago geratuko litzatekez, aurreko puntu erdiak kenduta, batez be, askotan gertatzen denez, puntu bat edo beste erdi trabes edo bortxaturik edo zetara datorren ez dakigula aurkitzen denean. Baina erreparo honeik eta guzti be, neurri luzeek bat-batean euren tentsinoa eta emozinoa sortzen dabe, batik-bat ale onak urteten dabenean. Beste kontu bat da danek luze bila jotea. Oso goi mailetan izan ezik, sei puntutik gorako neurriak, behartua barik, galazoa izan behar leuke.

Bertso jarrietan ez dago bat-bateko tentsino gehigarririk. Kalitatearen bila jo behar da, neurri luzeko sortetan ia ezinezko dena, ze bi aukera dagoz: betelan luzea egin ala dana edukiz kargatu. Lehenengo aukeran, bertsoak jarten hasteak ez dauka zentzunik, gero betelanez hornitzekotan. Bigarren aukeran, barriz, puntu guztiak edukiz kargatzeak bertso irunskatxa, okagarria ekarriko dau. Artea ez da, hainbeste, elementuen pilakuntza, selekzinoa baino. Neurri luzea pasagarri izan daiteke bertsogintza deskriptiboan edo narratiboan, pasarte eta xehetasun askoko kondaira dagoenean, baina orduantxe be, errima zorrotz samar eroan gura bada, oinen errepika azkenerako, hoskidetasun atsegingarri barik, mailuketa durditzaile bihurtzen da. Ideiak edo sentimentuak azaldu gura direnean, barriz, edo betelan zentzunbagea egiten da, edo eduki astunegiz kargatzen da, batez be bertsoak sortan doazenean, gehienean izan ohi denez.

Ahapaldi batek, puntu bat edo beste kenduta, ezer gitxi galtzen badau, seinalea ez zela hain ona. Puntu batzuk kenduta, orekan eta adierazmenean irabazi egiten badau, barriz, orduan seinalea oso txarra zela. Horrexegatik dira txarrak neurri luzeko bertso sorta gehienak. Gehienak dinot, salbuespenei aterik ez ixteagaitik, baina ez dakit neurri luzeko bertso sorta onik posible den be, oin denak errima berekoak direla behintzat. Bederatzi puntuko laburraren kasua aparte kontsideratu behar da. Nahizta puntuen kopuruz «luzea» izan, silabaz edo espazioz laburra da.

Txarra izan daiteke, baina ez astuna, ezin baita esplikazino handirik garatu. Errima aldetik, barriz, oso gatxa da natural eroatea, ariketa bat egiten ari zaren itxurarik emon barik. Horregaitik, bederatzi puntuko labur ondo eginak beti jarraituko dau bere gradua eta lilura eukitzen.

Nire doinurik luzeena «naufragoarena» da, hamarreko handiak baino zortzi silaba gehiago daukazena, baina berez eta nire lehen asmoan, «Anbotorekin trukean» izeneko sortan, oinak puntu sorta bitan banantzen dira, bost era batera eta erdiko hirurak bestera errimatuz. Orduan zortzi oin bardinen segida zunkaria hausi egiten da. Larogeta biko txapelketan, bat-batean lehenengoz erabili nebanean, (naufragoaren gaia), zortzi oinak era batera egitea erabagi neban, bildur bainintzen epaimahaia ez ete zen desorientatuko eta batez be ziur bainengoen (eta nago gaur be) gehienek zortzi oinak errima bakarrean egitearen «mailuketa» gehiago baloratzen dabela. Hori ez da inondik be neure ustea, baina, epaimahairako kantatzen denean, besteen ustea dela uste denari be begiratu ohi jako. Bederatziko luzea behin erabili izan dot Bizkaiko txapelketa batean, ez asko konbentzitzen ninduelako, epaimahaian haxe baloratzen zela banenkielako baino.

Bat-batekotik jarrietara itzulita, behin bakarrik erabili dot bederatziko laburra, ordainak neurri berean bihurtzeagaitik. «Naufragoarena» pare bat sortatan eta errima bikotxez. Beste guztietan, gehienak sei puntutik beherakoak dira. Ez dot ukatzen garai batean neurri luzeagoetarako joeraren abiarazle edo «errudun» izan nintzenik, baina harrezkeroko enpatxuaren fardela ez da nirea. Nire erizpide estetikoetan eta besteen ustezko ustearen presino barik erabagiten dodazen bertso jarrietan, ez dago neurri luzeakazko ongurarik.

- Euskalkiagaz kontraesanean ez dagozen kontuetan, batuaren araubidetik jotea erabagi dot.

- Oro har, euskera batuaren deklinabidea onartu dot.

- N-L kontsonanteen aurretik araua aplikatzen dot: *den, dauen, genduen, daikeen, ginen, nebazen, daroazen...*

- *Dodaz-ditut, nebazen-nituen...* forma bikotxetan, gehienik lehenengoa darabilt, baina baita bigarrena be inoz, kontestu hurbilean ez nahasten ahaleginduz.

- Aditzen hirugarren pertsonetan, Z adierazleari eustera jo dot: *zetorren, zegozen, zekien, zekarren, zeiten, zeikeen*, mendebaldeko zati handi batean egiten denari jarrai. Erizpide hau ez dot aplikatu aditz laguntzaile trantsitiboan (*eban, eustan...*), nahizta mendebaldean eta harago be Z-dun formak (*zeuen, zeurien, zeban, zestan...*) oso zabalduak izan.

- Aditz intrantsitiboen flexinoetan, hirugarren pertsonan D ezaugarriari bihurkatu barik eutsi dautsot, mendebaldeko egikera zabal batek egin ohi dauenez: *datorko, dabilku, dagotzu...*

- Laguntzaile trantsitiboaren flexinoetan, irregulartasunak ahalik gehien batzera jo dot, aditz gorputzari beti DAU forman eutsiz eta datiboari beti "O" ezaugarria aplikatuz: *dautsot, dautsodaz, neutson, baleutso, nekartson...*

- Azpi-euskalkietan sartzean, J hizkiaren hiru ahozkerak idazkeran honela bereizten dodaz: Y (y grekoa), J (jota espainola) eta JJ (jota frantsesa). T hizkiaren hiru ahozkerak honela adierazoten dira: T, TT eta TX.



BERTSOLARI liburuak

1
BIZIAREN AZALA
(XX. MENDEKO IPARRAGIRRE)
Xanti Iparragirre

2
ENAZ BANAZ
Xabier Amuriza

3
JOXE AGIRRE: MOZKETAREN MAISUA
Joxean Agirre | Jexux Murua

4
JON LOPATEGI, BERTSOZKO MEZULARIA
Luis Baraiazarra

5
BERTSOAREN AZTERBIDEAK
Joxerra Garzia

ZAILDU GABEAK
BILDUMA

1
OSABA TXIRRITA
Joxean Agirre

2
FERNANDOREN HERIOTZA AMEZKETARRA
Koldo Izagirre

3
NIRE UZTAPIDE
Pako Aristi